*2007an Izen Geografikoen Normalizazioari buruzko Nazio Batuen 9. Konferentziak ebazpenean toponimoak, leku izenak, alegia, kultura-ondare ukiezin edo inmaterialaren parte direla zehazten du.*

*Honek esan gura du administrazioek babestu behar dutela eta artez erabili. Honetaz gain, gure Legeek zehazten dute toponimoak, euskarazkoak badira, euskaraz idatzi behar ditugula, eta erdarazkoak izatekotan, erdaraz.*




Berrizko Baserriak







# Berrizko Baserriak

*Jon Ander Ramos Martínez (zuzendaria)*
*Ana Isabel Ugalde Gorostiza*
*Mikel Gorrotxategi Nieto*









***Jon Ander Ramos Martínez***
*(Ergüin, 1978).*
*Historian lizentziatua. Ikerlaria, Ikasketa Aurreratuetan diplomatua. Azken urteetan Euskal Herriko Unibertsitateko Amerikako Historia sailean ikerlari dihardu, aro garaikideko euskal emigrazioetan aditua izanik.*



***Ana Isabel Ugalde Gorostiza***
*(Arrasate-Mondragón).*
*Artearen Historian doktorea, Historian lizentziatua eta Magisteritzan diplomatua. Egun Euskal Herriko Unibertsitateko irakaslea da. Euskal Herriko Ondarea eta Ondarearen Hezkuntza ditu ikerketa gai.*



***Mikel Gorrotxategi Nieto***
*(Bilbo, 1963).*
*Euskal filologian lizentziatua, euskaltzain urgazlea eta Euskaltzaindiako Onomastika batzordeko kide eta idazkaria da. Azken urteetan toponimiaren alorrean burututako hainbat ikerketak bideratu ditu, gai honen inguruan zenbait liburu eta artikulu argitaratu dituelarik.*

indizea

## 1. ATALA



## 2. ATALA



## 3. ATALA

*Poz haundiz aurkezten deutsuet gure udalak bultzatu eta argitaratu dauan "Berrizko Baserriak" izeneko liburu hau. Aurreko udalbatzak eskaini eban bekari esker toponimia ikerketa lana egin zan.*

*Jon Ander Ramos historialariari emon geuntsan lan horren ardura eta orain, Ana Isabel Ugalderekin eta Mikel Gorrotxategirekin ikerketa horretatik abiatuta, liburu hau osotu dabe Berrizko leku-izenak ezagutzera emoteko.*

*Ikerlan honen helburuetako bat toponimoak berreskuratzea eta gizarteratzea izan da. Bestetik, toponimoak egungo euskerearen arau eta moldeetara ekartzea, liburu honetan batu diranak izango direlako, hain zuzen be, ofizialak eta normalizatuko diranak. Eta azkenik, gure baserrien eta bere balio arkitektonikoen katalogoa osotzea; argazki, ezaugarri eta toponimoekin.*

*Izan daitela liburua gero etorriko diran ikerketa barrien oinarri. Oraingook eta gerokook, gure herria eta baserriak hobeto ezagutuz, Berriz maitatzen jarraitu daigun.*

*Berrizen, 2013ko zemendian.*

*Rolando Isoird Refoyo.*
*Berrizko alkatea.*




*Erroteta aldea 1772an (Valladolideko Errege Txanzileriko Artxibategia, ARCV, Planos y Dibujos, Desglosados, 676, 1772).*

*Bost urte pasatu dira Berrizko toponimia ikerketa hasi genuenetik; eta ia urtebete, ikerketa horren emaitzak plazaratu zirenetik. Herriko mapa toponimikoa eta herritarren bidelagun izango diren auzo-panelak. Beraz, ibilbide luzeko lana da eta tartean, makina bat pertsona ibili gara.*

*Behin datu-bilketa eginda, mapa toponimikoa egin genuen eta bertan jasotako datuak gizarteratu nahi genituen. Irakurlearentzat interesgarria eta atsegina izango zen liburu bat egitea pentsatu genuen. Ahalegin handia egin arren, zu, irakurle, hurrengo orrialdeak bistaratu eta gero, izango zara gure lana baloratuko duena.*

*Arestian aipatu izan dugun moduan, ikerlan honetan lagun asko aritu gara. Etxez etxe joan gara eta toki guztietan harrera ona egin digutela azpimarratu nahi dugu.*

*Liburuan modu batean edo bestean bidelagun izan ditudan pertsonen ekarpenak goraipatu nahiko nituzke. Familia aipatu nahiko nuke, azken finean eurei zor dizkiet toponimiaz zipriztinduriko orduak eta orduak. Nola ez! liburu hau "eraikitzen" nire ondoan egon diren Mikel Gorrotxategi eta Ana Isabel Ugalde. Mikel eta biok izen guztien azalpenak atontzen ibili garen bitartean, Ana Isabelek baserrien ezaugarri arkitektonikoak landu ditu. Berrizera bueltatuz. Udaletxeko langileei be eskerrak, urte hauetan etxekoa banintz moduan hartu nautelako, eta nola ez proiektu honetan sinestu eta bultzatu duten zinegotzi zein alkate desberdinei. Era guztietako ekarpenak egin dituzten Maite Gerenabarrena, Amaia Arbulu eta Josu Orbeaskoa, amaierako produktua hobetzen guztiz baliagarriak izan direnak. Garaiko Momoitiotik datorkigun Lazaro Milikua idazkaria be aipatu nahi dut. Egunen batean barnean, buruan daraman altxorra aterako dugu. Sarrerako hitz hauek amaitu aurretik, Jose Luis Lizundia euskaltzain emeritua aipatu nahi dut. Urte hauetan toponimiari "eskainitako" orduen nolabaiteko "erruduna" baita. Zenbat berbaldi Berriz eta, oro har, Durangaldeko toponimia, historiaren gainean. Bihotzez eskerrak, kafe osteko solasaldi "magistralengatik".*

*Lehen aipatu izan dugun moduan, liburu honek lotura zuzena du 2008-2012 tartean burututako ikerketa toponimikoarekin. Ikerketa hau Berrizko Udalak ordaindu du baina ezin dugu ahaztu Euskaltzaindiaren gidaritzapean egin dugula, gorago aipatu dudan Mikel Gorrotxategirekin eta Akademiari lagundu dion Eudel erakundearekin.*

*Amaitu baino lehen, gaizki eginak konpontzeko eta hutsuneak betetzeko, irakurlearen laguntza bihotzez eskertuko nuke. Zuzenketak eta iradokizunak euskara zerbitzura bideratu eta argazkiak izanez gero, horiek ere helarazi. Lan honek, zuek nahi baduzue behintzat, jarraipena izango duelako….*

*Jon Ander Ramos Martínez.*

*Markesaren Palazioan, bi mila eta hamahiruko*
*irailaren hogeita bederatzian,*
*Done Mikel egunean.*

*"Seis cofradías hacen Berriz" tituludun artikulua idatzi nuen "El Correo de Vizcaya" gehigarrian 1974ko irailaren 28an. Beste txosten bat, Euskalerriko Erret Adiskideen Elkarteak, "Las formas de poblamiento en el Señorío de Vizcaya en la Edad Media" simposiumean irakurri nuen Bizkaiko Bibliotekan "La cofradía una entidad olvidada en el poblamiento de Vizcaya", 1978an, Bilbon, Elkarteak argitaratua.*

*Hain zuzen, oraintsu irakurri dugu Zeanuriko kofradiez prentsan, zeinetan uste zen Arratiako kontu bat bakarrik zela. Ba ez, Durangaldean ere izan dira, gehienbat Iurretan kontserbatu direlarik, "kofradia basoen" herri jabegoaren auziagatik. Sei dira Iurretan, sei, baita ere, Abadiñon. Argi dago, kasu honetan, sei izan direla Berrizen ere, ez bat gehiago, ez gutxiago. Bost, Mallabian; lau, Mañarian; hiru, Sanagustinetxebarrian.*

*Eta, goazen, hitzaurre honetan kofradiaz kofradia gaia aitzakitzat hartuta.*

## *Andikoa*

*Andikoaz, aspaldi, 1966ko ekainean, Gerediaga aldizkariaren 2. zenbakian artikulu bat "La Andra-Mari de Andicona y la Merindad de Durango" argitaratu zen Kepa de Hermodo pseudonimoaz. Bestalde, nire gazte sasoia datorkit gogora, zeinetan joaten ginen neska-mutil koadrila bat Matienatik Andikoara Asentzio jaietan. Argi geldi dedila, abadiñar euskaldun zaharrok sekula ez dugu esan kofradia honen izena "n"rekin.*

*Oker ez banago, Berrizko toponimia proiektuari buruzko lehen bilera 2008ko martxoaren 3an egin genuela, bertan epaimahaiko Karmen Ametzua zinegotzia, Lazaro Milikua udal idazkaria, Mikel Gorrotxategi Euskaltzaindiko Onomastika Zerbitzuko arduraduna eta lauok ginelarik. Aurkeztu zirenetatik Jon Ander Ramos aukeratzea erabaki genuen aho batez. Ez naiz damu, zeren eta toponimia lanetan ikerle asko ezagutu ditut, baina, esan dezaket, ene ustez, besteei merezimenduak kendu gabe, onenetarikoa suertatu dela.*

*Bestalde, une honetan bere doktorego tesia egiten dihardu, gaia Habanako Asociación Vasco-Navarra de Beneficencia eta Kubako euskaldunak XIX. mendean delarik. Berrizko toponimia lana bikain burutu du, historia sakonki aztertuz, artxiboak zeharo miatuz, sei kofradietan lekuko aproposak elkarrizketatuz, baserriz baserri ibiliz, ahantzi gabe Olakuetako kaleak euskararen arloa hasieran beldurrez hartu bazuen ere, ez baita filologoa, bide erdia baino lehenago, ondo dominatu du. Egin zaizkidan galderak, elkarrekin igaro ditugun orduak, fede ematen dit, berari hori aitortzeko.*

## *Eitua*

*Eituaz baditut gomutapen ugari. Traña-Matiena mugakide izanda, beti eduki dugu harreman handia. Abaroa (Aboro), Belakortu eta, batez ere, Zubitxuetako Gorroñotarrekin harremanez gain, adiskidetza sakona. Ereñagako "herriko taberna" ere ez zen gutxi bisitatutakoa.*

*Toponimiaz zer ikusi zuzena duen ekintza bat aipatu nahi dut: Geregiaga Elkartearen bidez – zeinetan lehendakari zen Balendin Lasuen, Eituan lantegia zuena; lehendakariorde, Luis Gorroño eituarra eta ni, elkarteko ida-*

*zkaria - proposatu genien Berriz eta Abadiñoko udalei industria poligonoak N-634 errepide ertzean seinalizatzea eta hala onartu eta egin zuten EITUA eta LEBARIO toponimoak jarriaz. Hain zuzen, jendea "el polígono de al lado del Pastor de Gorbea" eta holakoak esaten hasiak ziren.*

*Toponimiaren garrantziaz, nik baino hobeto Francisco José (Paco) Llera, Euskal Herriko Unibertsitateko katedradunak adierazi zuen "LLETRES ASTURIANES" aldizkariaren 13. zenbakian. Hara hor Llera irakasle asturiarrak zer zioen pasarte interesgarri batzuetan: "Identidad colectiva y territorialidad. Me voy a mover, por lo tanto, en el terreno de la valoración social que la colectividad da a la denominación del espacio físico (toponimia) sobre el que se asienta desde no sabe cuándo. Estamos ante un problema sociocultural, en el que cotidiana e inconscientemente se simbolizan o se reproducen la identidad colectiva de un pueblo y su territorialidad. Si hay algo que condensa tras de si la toponimia tradicional, es un proceso sociocultural por el que cada grupo humano denomina y domina su espacio natural, en el marco del universo simbólico de sus representaciones colectivas… Con la construcción estatal de tipo imperial y absolutista se va produciendo una centralización política y, lo que es más importante, se genera una dinámica de relación conductiva que se puede denominar centro-periferia. Indudablemente, la dinámica centro-periferia tiene componentes políticos, militares, económicos, territoriales y socioculturales. Va a ser, en definitiva, sobre el territorio o la territorialidad donde se va a librar una batalla histórica por la conquista del centro o la centralidad del conjunto de significados culturales, que constituían las representaciones colectivas de los pueblos peninsulares… En nuestro peculiar proceso de centralización político-económica y de descentración cultural de los pueblos o sociedades peninsulares, lo que se produce es un desplazamiento de los valores culturales por la nueva cultura política castellana, que sirve de envoltorio y de vehículo de la expansión del Estado unitario… Esta particular usurpación toponímica puede ser que no sea, ni más ni menos, que el último eslabón de ese proceso general, que podemos denominar con G. Heraud "alienación étnica" y, que se puede definir como dominación desde fuera a distintos niveles (político) demográfico, lingüístico-cultural, económico, territorial y psicológico. En tal proceso, la recuperación de la toponimia tradicional asturiana, en cuanto condensa y simboliza el maridaje de la lengua y el territorio autóctonos, resulta una labor en absoluto desdeñable y, seguramente básica, cuando está casi todo por conseguir" .*

## ***Murgoitio***

*Murgoitioz hiru oroimen labur ditut : umetako Askondotarren nire senitartekoena; Matienara etorritako lehen abadearena, hain zuzen, Murgoitiobeñako Juan Pedro Zelaietarena, zeinekin adiskidetasun sakona izan nuen gerora ere; eta, azkenik, Angel Terol eta bere bikote Ana Urkijok, zeinek beti Aingeru deitzen zion, nire aholkuz eta ez Gotzon. Terol ez zen Euskal Herrikoa, baina bai herritar progresista eta integratua. Murgoition eraiki zuen etxe berria, ilusio handiz, baina gaixo larri batek jota, Murgoitioko bere etxe berriaz gozatzera ere ezin izan zuen iritsi. Etxeari, AINGERUENA oikonimo jatorra jarri zioten, ordea.*

*Euskaltzaindiak, Institut d'Estudis Catalans eta Real Academia Galegako hiru Onomastika Batzorde kideok hiru bilera egin genituen Bilbon, Santiago de Compostela eta Bartzelonan. Arazoa zen Real Academia Españolak bere DRAE hiztegi famatuaren 7. apendizeak gaur legezko ez diren hiru autonomiadun nazionalitateetako herri izenak gaztelaniazko erara zekartzela. Lehengo bileraren ondorioz, Madrilgo prentsa zentralista eta akademiko ultra banaka batek hautsak harrotu zituen. Bigarrengoan, Santiagokoan, RAEko zuzendaritzari eskatu zitzaion erretiratzeko Apendize zorigaiztozko hori eta, hala onartu zuen, zorionez. Compostelako horretan, kazetari batek, mahai buruari, hots, Antón Santamarina, galizieraren Akademiako Onomastika batzorde buruari honako galdera egin zion: "¿Cómo no le han invitado a la Comisión de Onomástica de la Real Academia Española?. Galegoaren erantzuna: "Es que no la tiene señorita, porque no le hace falta. Es el Estado español, quien durante dos siglos ha castellanizado los topónimos catalanes, vascos y gallegos. Y ahora, nos toca a nuestras tres academias investigar y normalizar, entre otras cosas, nuestra toponimia. Además es lo que nos encomiendan nuestros respectivos Estatutos de Autonomía al oficializar el catalán, el vasco y el gallego."*

*Administrazio desberdinen eginkizuna da, ondorioz, normalizazio ikerketa lanak babestea. Estatukoagandik ezer gutxi espero dugu, baina, bai, autonomia, foru eta udal administrazioengandik. Horregatik da txalogarria Berrizko udalak Jon Ander Ramosen lana babestea. Durangaldeko ia udal gehienak eman dute babes hori eta euskaltzale erresponsabilitatez animatzen ditugu falta direnak.*

## *Okango*

*Okangoz umetako oroimena dut, hots, Mekolaia (Mekola) baserrira sarri joaten nintzelakoz, nire izeko Sofia Aiartzaguenaren jaiotetxera. Eta umetako gauzak ez dira ahazten. Geroago, Akonastegiko Lejarretatarrekin, bereziki, Nestorrekin izan dut harremana.*

*Leku-izenak normalizatu ahal izateko, oikonimoak (etxe-izenak) ezinbesteko baldintza hizkuntzaren ofizialtasuna da. 1980 urte arte, salbu 1936-37ko Euskadiko Agintaritzaren 9 hilabete salbu, Euskal Herriak ez du euskararen aitormen ofizialik izan. Euskal Autonomiaren Erkidegoko autogobernu Estatutuaren 6. artikuluak, frankismoaren errepresioa ezagutu genuenontzat, amestu ere ez genuen aitormena eskaini zigun: 6.1. "Euskarak, Euskal Herriaren hizkuntza propioa denez, hizkuntza ofizialen maila izango du Euskal Autonomia Erkidegoan gaztelaniarekin batera eta guztiek dute bi hizkuntzak ezagutzeko eta erabiltzeko eskubidea... "Eta segitzen du beste lau lerrokadetan.*

*Baina, garrantzitsuena, leku-izenen arlorako, Euskararen Legeak, Parlamentuak, hots, Eusko Legebiltzarrak onartutako 1982/10 Legeak, bere 10 artikuluak dioena: " 10. 1, Autonomia Erkidegoko lurralde, UDAL, herri entitate, geografia izendegi, hiribide eta, oro har, leku-izen guztien izen ofizialak Jaurlaritzak, Lurralde Historikoetako Foru Erakundeek edota TOKI ERAKUNDEEK finkatuko dituzte, bakoitzak berari dagokion aginte-eremuaren barruan eta, beti ere, JATORRIZKO IZEN EUSKALDUN, erromantzezko*

*edo gaztelaniazkoari, hizkuntza bakoitzari dagokion grafia akademikoari men eginaz. ...”*

*Ondorioz, Berrizen jatorrizko ia leku-izen guztiak euskaldunak direnez, Jon Anderren ikerketak balio erantsi izugarria izango du administrazio desberdinek bete dezaten 10. artikulu horren lehen lerrokadak agintzen duena. Elebitasuna, ordea, erreserbatzekotan, bakarrik generikoetarako aipatzen du 2. lerrokadak, ez ordea, toponimoetarako. Adibidez: norabide aldaketa/ cambio de sentido eta holakoetarako.*

## *Sallobente-Mendibil*

*Kofradia honetan gehien bisitatu dudan etxea, “Ganeketxe” izan da ez bakarrik taberna&jatetxeagatik, baizik eta bertako seme Jose Inaziogatik, biok izan ginen elkarrekin Gerediaga Elkartean, frankismoaren azken ostikadak jasanaz, biok “Tribunal de Orden Publicora” joan behar izan genuelako, bera, elkartearen lehendakari legez inputatu gisa eta, ni, idazkari nintzenez, lekuko eta laguntzaile bezala.*

*Liburu hau etxe izenei buruzkoa da, hots, onomastika esparruko, oikonimia espezialitatekoa. Eta honek badu beste garrantzi bat gure kasuan, alegia, itsas isuriko deitura edo abizen gehienak, etxe izenak direla. Deituren sailkapena, Alemaniako Treveris/Trier hirian 1993 urtean egindako ICOS (International Congress of Onomastic Sciencies) delakoaren biltzarrean, ikasi nuen: patronimikoak, oikonimoak, jentilizioak, ofiziozkoak, gaitzizenak, toponimikoak eta abar. Gure herrialdean, hau zen orokorrena, oikonimoena, alegia, etxe izenena.*

*Horretarako guztiz adierazgarria da liburu honetan agertzen diren Berrizko etxe izen asko, bertatik sortutako deiturak/abizenak baitira. Batzuk: Ibarra, Agirre eta abar, oinetxe (casa solariega) leku askotakoak dira, baina, beste batzuk Berrizko jatorri propiokoak. Hara hor, batzuk aipatzearren: Agirresakona, Basagutxibeaskoa, Bilbatua, Lupiola, Zugatza, Belakortu, Ereñaga, Isuntza, Arroitajauregi, Aroitaonandia, Gomendiourrutia, Gomendiozelaieta, Murgoitiobeña, Zubierrementeria, Olabegoia, Abaitua, Aretxaga, Arriortua, Batarrita, Besoitaguena, Besoitaiturria, Besoitaormaetxea, Larizgoitia, Sarrionandia, Sarriortuzar, Sarriugarte...*

*Orain, legez, deiturak katalan, galego eta euskarazkoak gure hizkuntza propioaren arabera idazteko aukera dago eta oso onuragarria suertatzen da liburu hau. Honek arazo zenbait sortzen ditu, liburu honek normalizatzeko bidea erakusten duelako, zeren eta tradizio erdalduneko grafiatik, gaur egun ahoskatzen edo laburtzen den forma ezin dela erregistratu. Berrizko deitura entzutetsu bat aipatuko dut: SARRIONANDIA, berriztarrek eta garaitarrek “Sarrionandidje” ahoskatuko dute, ondorioz, horrela idatz daiteke? Edo, “Basutxibiskue” esaten delako Andikoako etxe bat, horrela idatzi behar da? Ez duda barik, Basagutxibeaskoa forma jasoan. Adibidez, Andaluziako probintzia izenak, bertan “Cai”, Zebiya, Graná ahoskatzen dituzte, baina badakite idazkera normalizatua Cádiz, Sevilla eta Granada direla. Kontura gaitezen euskararen ofizialtasun eta normalizaziorik ezaz, euskal analfabetoak izan garela gehienok.*

## *Sarria*

*Sarriaz harreman kontua baino ezagupidea gehiago izan da. Behinolako Arrierrekaren ibilbide interesgarria egin nuelarik, hasi Arriko Olatik, Berrizko partean Anportan amaitu arren, Ezterripa eta Lebariojauregin Zalduerrekarekin bat egin arte. Urdaiagako Asentzio kofradia jaietan ere maiz egona naiz.*

## *Amaitzeko, ondorioak eta eginkizun zenbait adiskide berriztarrontzat:*

- *Udalarentzat: Kofradiak, auzo txikiak, kaleak, poligonoak, kiroldegiak, eskolak, eraikuntza publiko oro, ondo seinalizatzea. Oraintsu, eskualdeko udal arkitekto bati ohar arazi nion, nolatan udalbatzak poligono baten izena onartu eta seinalizatu gabe egotea, ondorioz, garraiolari eta bestelakoak, despistatuta ibiltzen zirelarik. Handik laster kartela jarri zuten.*
- *Etxe jabeentzat: liburu honen argibideak jarraitu eta horren arabera seinalizatu. Etxe berriak egiten dituztenentzat onuragarria litzateke izen jatorrak jartzeko bertako ereduak jartzea eta ez batzuen kapritxoz txarto asmatutako izenak. Agian, udaletxeko euskara teknikariaren aholkua eskatu beharra ez legoke gaizki.*
- *Herritarrentzat: deiturak euskal grafia akademikoaren arabera erregistratzea, edozein hizkuntza normalizatuetan egiten den moduan.*
- *Eskola maisu-maistrentzat: umeei Berrizko ondare preziatu hau irakastea, beharrezko balukete, hitzaldi edo ikastarotxo bat aurretiaz hartuta. Euskararen normalizazioan hezkuntza baita alorrik garrantzitsuena eta, hori, irakasleen esku dago eta eskergarria izango da zuon pedagogia lana.*

*Jose Luis Lizundia Askondo, euskaltzaina.*

*Hemen aurkezten den liburuxka hau Berrizko Udalak, Euskara Sailaren ekimenez, herriko toponimia biltzeko Euskaltzaindiarekin sinatutako hitzarmenaren ondorioa da. Ikerketa apal baten ostean Berrizko leku-izen nagusienak bildu dira herriko mapa toponimikoan. Edozelan ere, leku asko, hainbat baserri eta etxe berbarako, desagertu egin dira aspaldian, hirigintza aldaketak direla-eta edota beste arrazoi batzuengatik. Izen horiek herritarren memoriatik desagertzeko prozesua geldiaraztea izan zen, hain zuzen ere, ikerketari ekiteko arrazoi nagusia. Lanaren emaitzak ahalik eta aberatsenak izan daitezen, Berrizko leku-izenen gaineko informazioa eta dokumentazioa bildu da; besteak beste, Berrizko Udal Artxiboa (Errolda desberdinak, 1859ko Udal Izendegia eta baso, landa eta uren gaineko fondoak), Bizkaiko Foru Aldundiko Artxiboa (1705, 1745 eta 1796 Bizkaiko Fogerazioak, 1825. urteko Polizia Errolda), Bizkaiko Artxibo Historiko Probintziala (Berriz elizateari dagozkion 1862. urte arteko Erregistro liburuak) eta Durangoko Jabego Erregistroa (Berrizko Liburuak, 1863-1908).*

*Toponimia lan horretan jasotako informazioarekin, eta bertan agertzen diren leku-izenen normalizazioa gizarteratzeko, baserri, ermita, eliza, erreka, landa eta baso izenak bildu dira lan honetan eta herritarren eskura jarri, herritarron ondarea delako. Izan ere, Udalaren helburua Berrizko bizilagunek herriko leku-izenak hobeto ezagutzeaz gain, behar bezala zaintzeko bidea zabaltzea izan da.*

## ***Toponimia hizkuntza ondarearen altxorra***

*Erdi Aroan sortu zen Berriz, eta mendez mendeko garapen demografikoa izan du, mantsoa azken mendean, batez ere azken hamarkadetan izan duenarekin konparatuta; izan ere, sano aldatu da Berrizko udalerria eta bertan bizi diren biztanleen bizimodua azken garai hauetan. Aldaketok, garai batean herri honetako bizilagunek zituzten erreferente geografikoak aldatu ez ezik, erreferenteon garrantzia ere gutxitu egin dute. Gaur egungo GPS tresnek edo errepide eta kale seinaleztapenek inguruan ditugun leku-izen asko eta asko baliogabetu egin dituzte. Gaur egungo bizilagunoi, ondorioz, gatza egiten zaigu iturri bati edo etxe ondoko belardiari izena ematea, izendatzea edo erreferentzia gisa erabiltzea. Gure erreferenteak kaleak, eraikin handiak, errepideak edota dendak dira; baina, garai batean, halakorik ez zegoenean, landa, ermita, gune edo baserriek zuten eginkizun hori. Gure arbaso zaharrek duela zenbait mende edota zenbait hamarkada sortutako izenak dira horiek, helburu praktiko bati erantzunez sortutakoak eta, nola ez, euren hizkuntzak ematen zizkien baliabideak erabilita. Horrela jaio ziren bada leku-izenak ere Berrizen, bertako bizilagunek sortu zituzten izenak, leku jakin baten ezaugarriak gogoan hartuta eta berori izendatzeko premiari erantzuteko asmoz.*

*Neurri handi batean herritarrak ziren, eta ondorioz herria, lekuak izendatzen zituztenak. Gaur egun ordea, indibidualagoa da lan hori, eta etxeen jabeek eta abar dira euren jabetzako lekuei izena ematen dietenak.*

*Esku artean duzun liburuxka honetan Berrizko leku-izen esanguratsuenez arituko gara, baina ezer baino lehen, hausnar dezagun leku-izenen garrantziaz eta hemen aurkeztuko ditugun emaitzen nondik norakoez.*

## *Toponimia zer da eta zertarako ikertu*

*Toponimoak leku-izenak dira (grekerazko topos 'leku' + nomos 'izen'). Gure inguruko edozein lekuk izan ohi du izena Euskal Herrian: etxaldeek, errekek, soroek, belardiek, tontorrek, trokek, auzoek, mendi-maldek eta abarrek. Arestian aipatu izan dugun moduan azken urteetan egindako ikerketa-lanaren ondorioak dira hemen aurkeztutako emaitzak. Ikerketak iraun duen bitartean, Berrizko leku-izenei buruzko informazio eta dokumentazio ugari bildu dugu. Halakoetan egin ohi den bezala, dokumentazio zaharra biltzeaz gain, leku-izenen ikerketa honetan berriztar batzuek ere modu aktiboan hartu dute parte, eta euren memorian gorderik zuten informazioa gure esku jarri dute, eta zalantzarik ez izan, euren laguntza eta ekarpenik gabe lan honek ez zuela eman dituen emaitza aberatsak emango. Honenbestez, esker mila, informazioa eman eta ekarpenak egin dituzten guztiei, baita lan honetan, era zuzenean edo zeharka, parte hartu duten gainerakoei ere.*

## *Toponimia arautzearen garrantzia.*

*Horrela, bada, historian zehar izenek aldaketa ugari izan dituzte: batetik, euskararen eboluzio diakronikoaren ondorioz, ahoskera ezberdinak izan dituztelako, eta idatzizko jatorrizko forma osoa aldatu dutelako ahozko erabileran; bestetik, izen asko eta asko, hamaika arrazoi dela eta, beste izenen batengatik ordezkatu egin direlako sarritan. Hain zuzen ere, leku-izenen desagertze-prozesu hori geldiaraztea izan da leku-izenen ikerketari ekiteko arrazoi nagusienetakoa.*

*Ezagutzen ditugun leku-izen horien idazkera egokia eta jatorrizko forma zein den jakitea ere izan du helburu ikerketak. Toponimia hizkuntzaz baliatzen denez gero, hizkuntzaren atala da, eta ondorioz, euskarazko toponimoak euskara berak bizi duen normalizazio prozesuan parte hartu behar du. Horrela, bada, hizkuntza arruntaren eta bere lexikoaren eta gramatikaren erabilera eta grafia arautzen dugun bezalaxe, toponimoen idazkera ere arautze prozesu baten barruan dago. Eta arautze-prozesu horren arauemaile dugun Euskaltzaindiko Onomastika batzordeak oniritzia eman du Berrizko edozein toponimoren idazkera erabakitzerakoan, ahozko eta idatzizkoen artean formarik egokiena hautatuz; sarritan alde handia egoten baita betidanik ezagutzen dugun lekuren baten ahozko formaren eta jatorrizko idatzizko forma osoaren izenaren artean. Esate baterako, Atxa izenaz ezagutzen dugun Sallobente-Mendibil kofradiako baserriaren idatzizko forma egokia Aretxaga da, edo Uribe izenaz ezagutzen dugun auzunea, Uribe baserriaren izenetik dator.*

*Beste adibide bat aipatzearren Berrizko Sarrionaindia eta Arroitaonaindia baserriak dira. Jendeak bata zein besteari ahoz Onáindi esaten dio. Ahoz hori egokia eta jatorra da, bai euskaraz zein beste hizkuntzetan, baina idatziz eta bereziki gauza ofizialetarako izen osoa erabili behar dugu, ez nahaste-*

*ko. Demagun anbulantzia deitu behar dugula larrialdi baterako eta Onaindi esaten dugunez Sarrira joan beharrean Murgoitiora doala. Beste horrenbeste, nola ez, gerta daiteke suhiltzaileekin. Hau, jakina, ez da kasu bakarra eta, esaterako, Etxebarrirekin gauza bera gerta daiteke. Bizkaiko herri guztietan dago Etxebarri izeneko baserri bat edo gehiago, baita Berrizen ere. Aurreko adibideari jarraituz, larrialdiko dei bat eginez gero Etxebarrira etortzeko anbulantzia, beste azalpenik eman ezean zein Etxebarrira joango lirateke? Olabetxebarrira, Uribetxebarrira edo akaso Besoitaetxebarrira?. Hau ez da bakarrik Berrizen gertatzen, Bizkaia osoan gertatzen da. Esaterako Beaskoa ahoz "Bixko" eta Urizar ahoz "Uxar" ondoko herrietan ere, Mallabian esaterako baditugu. Horregatik bertan Zengotitabeaskoa, Beranourizar eta Gereaurizar izenak normalizatu dira.*

*Nolanahi ere, Euskaltzaindiak idatzizko forma baino ez du arautzen, horrenbestez, ahozko erabilera herriarena eta herritarrena da, euskal hiztunena alegia. Eurek janzten baitituzte toponimoak bertako euskararen eta euskalkiaren ezaugarriez.*

## *Toponimia Berrizko hizkuntza ondarea.*

*Bi dira toponimiak dituen balio nagusiak. Batetik, balio linguistiko neurrigabea du toponimiak; eta bestetik, balio historikoa. Hortaz, herriaren ondare paregabe bihurtzen zaigu, zaindu eta gorde beharreko ondarea. 2007an Izen Geografikoen Normalizazioari buruzko Nazio Batuen 9. Konferentziak ere toponimoak kulturaren ondare ukiezinaren parte direla zehazten du.*

*Euskara hizkuntzaren historia latza da, eta gutxi izan dira bere ibilbidean izan ditugun berriak. Toponimian, ordea, historia horren eta bilakaera horren aztarna ugari topatu ahal ditugu. Berrizko toponimia beraz, Berrizko euskararen aztarnategi ezin hobea da eta, besteak beste, udalerri erabat euskaldunaren irudia dugu. Toponimia historikoaren ia %100 euskalduna da Berrizen, eta horrek argi adierazten du Berriz eta berriztarrak nagusiki euskaldunak izan direla mendeetan. Baina, euskara eta gaztelaniaren arteko elkarbizitzak, eragin zuzena izan du toponimian ere, eta jatorrizko izenak aldatu edo desitxuratu egin dira elkarreragin horren ondorioz; fenomeno normala, bestalde, ukipen egoeran dauden hizkuntzetan.*

*Toponimiak erabiltzen zen lexikoaren berri ematen digu, ahoskerarena eta izenak sortzeko berriztarrek erabiltzen zituzten baliabideena; eta hori Berrizko euskararentzako balio handiko informazioa da, izan ere azken mendean bertako euskaldun kopuruak nabarmen egin du behera eta, jakina, horrek eragin zuzena izan du hizkuntzan eta toponimian.*

*Gaur egun Berrizek duen irudia azken mendean bizi izan duen eraldaketaren ondorioa da, industrializazioaren ondorioa, alegia. Berrizko leku-izenak, memoria historikoaren zein azken mendeko historia berriagoaren lekuko dira. Guztiarekin ere, Berrizek toponimia aberatsa du, eta ondare hori gorde beharra dago, bere historiaren lekukorik zintzoena baita.*

## izena baino gehiago
## berrizko etxeen arkitektura

*Arestian aipatu dugun moduan, Berrizko leku-izen nagusienak bildu dira herriko mapa toponimikoan. Eta ez dugu zalantzarik: izen horiek bilakatu dira herriak gorde eta mantendu beharreko altxor. Baina puntu honetara helduta, eta altxorraz dihardugunean, ez dugu ahaztu behar Euskal Herriko landa arkitekturaren ikurrik handiena: baserria. Berrizko herrian ere bai, baserri asko eta kalitate arkitektoniko handikoak zutik dirautelako bertan oraindik ere.*

*Baserriak, Euskal Herri hezean, eraikin trinkoak dira, handiak, familia batentzat eginak eta etxe bakar gisa jasoak, auto-hornikuntza bilatuz. Teilape batean egon ahal dira etxebizitza, korta, lantegia, dolarea, upategia, ganbara, lastategia, usategia eta beste hainbat.*

*Gaur egun baserritzat ezagutzen duguna Erdi Aroaren amaieran eratutakoa da, XV. mendea bukatzeko zegoela, aspaldiko etxea zegoen tokian. Horren berri izenek ematen digute, gehienak etxeak baino zaharragoak. Izena aitatu dugu eta esan beharra dago Euskal Herrian baserriek izena dutela eta ia beti mendeetan zehar iraun egin duela, etxearen jabeak aldatu izan arren.*

*Dirudienez, aurreko baserriak eraikin desberdinez osatuta zeuden edo, zehatzago esanda, txabola mordo batek. Hauen artean bereizten ei ziren bizitokia, dolarea, arnaga, upategia, ortua eta besteren bat, denak hesi batek inguratuta. Ganaduak, ostera, kortetan edukitzen zituzten, basoan, libre, eta korta horietan olak egiteko baimena izaten zuten, hau da, aterpe gisako txabolak, egurrezkoak, baserri-etxe bihurtuko zirenak baino eskasagoak. Autore batzuen arabera, Erdi Aroko baserritar batek ondo bereiziko zituen etxeak eta kortetako olak.*

### ***Baserrien sorrera***

*Aspaldiko baserriak eta olak egurraz jasotzen ziren; izan ere, egurra oso material arrunta eta ugaria da Euskal Herri osoan. Baina XV. mende amaieran harriak lekua jan zion egurrari eta harrezkero eraikuntza material nagusi bilakatu zen. Egurra ez zuten alboratu, euskarri moduan erabili zituztelako itzelezko tantai ederrak. Etxe modernoak ziren, ondo banatutako espazioekin eta horietan Frantzia, Herbehereak eta Alemaniako eragina sumatu dute adituek. Ez hori bakarrik, harrizko etxeak handiagoak izango ziren eta profesionalek egindakoak, harginek eta zurginek. Aldaketa izenek ere adieraziko zuten, Arria eta Besoitaormaetxea kasuan bezala.*

*Oro har, ahal den eguzki ordu gehien aprobetxatzeko, paraje eguzkitsuetan egon ohi dira, haize gordeetan eta, lautadetakoak izan ezik, erripa eta maldei egokituta. Sarri egiten duen euriari aurre egiteko, egurrezko oholtxoen ordez, buztinezko teilak erabiltzen hasi ziren, 24o-28o teilatuetan, gehienetan bi isuritakoak, laukoak eta miru-buztandunak be aurki daitezke.*

*Aldaketa iraultzaile horren arrazoiak ugariak dira. Aipa daitezke, besteak beste, jauntxoen arteko borroken amaiera; biztanleriaren hazkundea eta honen premiak asetzeko lur berrien beharra, ibarretako lurrak, animalien-*

*tzako barik, beste zeregin batzuetarako uztea, eta haiek etxe barruan gordetzea, libre utzi gabe.*

*Ogia egiteko gariaren eskariak ere gora egin zuen. Honi erantzuteko baserritarrek gari soloak handitu zituzten, nahiz eta klima hezea onena ez izan eta behar beste ez ekoitzi. Gari uzta gordetzea ere oso inportantea zen eta etxeei ganbara handiak egin beharra zegoen edo, ostantzean, arnaga edo garaiak aparte eraiki. Bildutako garia erreka ondoko errotetan ehotzen zen; eta urunaren eta labeetan egositako ogiaren salmenta diru iturri bihurtu ziren. Eta ezin gogoratu barik utzi urrutirako ontzietan eramaten zituzten opil airisak, legamiaz jagi gabeak, denbora gehiagoan irauteko.*

*Berrizko baserri askok gorde dituzte arnagak eta labeak etxe inguruan eta badira baserri bilakatutako arnagak ere bai. Arnagak ikusi daitezke, sarritan arrastoak baino ez, Andikoapariziorenean, Batarritan, Besoitaormaetxean, Gomendiourrutian, Isuntzabekoan, Matzagan, Olabebengoetxean, Sarriamatzan eta Ugartebidean. Baserri bihurtutako arnagak dira: Abaitualdekoa, Ametzualdekoa, Andikoa, Beñandikoa, Berrizbeitialdekoa, Besoita Etxetxikia, Olabeurigoenekoa, Uribealdekoa. Errotak izan ziren baserriak, tartean burdinola izandakoak ere bai, Abaroerrota, Anporta, Arriola, Bekoerrota, Belakortu, Bolunzar, Elexosterrota, Errotabarria, Errotatxu, Errotazarra, Erroteta, Goikoerrota, Larizkoerrota, Okabekoa, Okagoikoa, Olabezubiaurre, Olazarra, Ugalderrota, Ugarterrota eta Zubiganekoa.*

*Sagardogintzaren eragina ere ukaezina da XVI. mendean jasotzen hasi ziren baserri berrietan. Produkzioa oso handia zen eta autokontsumoa eta salmenta zituen xede. Etxe asko egurrezko dolare handia gordetzeko egin ziren eta, luze-zabal, haren arabera eraiki. Halakoak dira Besoitaormaetxea, Bilbatuaganekoa, Bilbatuazpikoa eta Sarrionandia, besteak beste. Bilbatuazpikoak upategia du oraindik, baita Bertoitak ere.*

*Ekonomiak ere hobera egin zuen nabarmen, Euskal Herrian eta Europan ere bai. Amerika aurkitzeak mundu berria zabaldu zuen eta harako zein Andaluziarako joera errotu zen oinordeko ez zirenen artean batez ere. Merkatu berriak irekitzeak izugarri lagundu zien garatzen burdinola, merkataritza eta untzigintzari, baita hauen inguruan eratutako beste lanbide guztiei ere.*

*Ameriketatik ekarritako artoak ere izan zuen islarik baserrietan. Garia ez bezala, oso ondo egokitu zen hona eta XVII. mendean zehar ekoizpena errotu zen. Hori dela eta, bizitzeko aukerak handitu egin ziren eta baserri berriak eraikitzera animatu. Izan ere, mende horretako ekonomia orokorraren beherakadak baserriak indartu zituen eta aberatsek negozio aukera moduan ikusi zituzten, hauen artean jabetza kontzentratuz eta errenteroen kopurua handituz, baserri asko eta asko bizitza bikoak eginaz. Etxe berriak dotoreak izango dira, material aukeratuekin egindakoak, obraren eragileen maila erakusteko modukoak.*

*Ekoizpenak gora egin bazuen ere, ez zen nahikoa izan denei jaten emateko, baserriko zein kalekoei, eta XIX. mendean beste ekinaldi bat egin zen baserrigintzan, ordura arte landu bako parajeetan, landa eta basoetan. Patata eta babak ereiteak beste aldaketa sakon bat ekarri zuen elikagaien produkzioan eta eguneroko jatorduetako protagonista izan dira urteetan zehar. Baserri etxe berriak, ostera, eskasagoak izango ziren gehienetan, asko olak edo arnagak aprobetxatuz jasotakoak.*

*Industrializazioarekin batera baserritar askok fabrikarako eta kalerako bidea hartu zuten. Eta geratu zirenentzat ugazabarekin izandako harremanak hobetu egin ziren, kontratuak egonkortu egin zirelako. Azkeneko urteetako bilakaera ezaguna da. Baserri askoren jabetza bertan bizi zirenen eskuetara pasatu da; beste batzuk, hustu; ekoizpenak aldatu; bizileku soil bilakatu eta gehienak, eraberritu, gaur egungo premietara egokitzeko.*

## Baserrien eraikuntza eta tipologiak

*Baserriek gaur egun daukaten itxura ez da askotan jatorrian izan zutena. Bizimoduko egoera berrietara moldatu beharra izan zuten, eta egokitzeko obrak egin ere bai. Gehienetan ez zuten egindakoa bota, berriaren berriz eraikitzeko, alde berriak gehitu baino ez. Horregatik ageri dira baserri asko hainbat gehigarri atxikita, batzuetan ahalegin berezia eginda fatxada nagusiak irudi bateratua izateko eta beste batzuetan, ordea, ardura hori barik.*

*Baserrietako fatxada nagusian kontzentratzen da bere indarra, bere marka, bere balioa. Han kokatzen dira sarrera nagusia, bizitokia, argiztatzeko eta aireztatzeko premia duten lekuak. Horregatik, hara zabaltzen dira baoak, orientazio egokia aprobetxatuz. Leiho eta balkoiak, saietera eta txori-tokiak, ganbarak, baita armarria ere, jartzeko aukera dagoenean. Sarri hegal zabaleko teilatuak fatxada nagusia babesten laguntzen du, behin baino gehiagotan beranduago jarriak, teilatuari eusteko besoak trabatzeko moduak adierazten duen legez.*

*Edozelan ere, baserrietan antzeman daitezke elementuak, moldeak, eraiki zireneko sasoiak gogorarazten dituztenak. Aspaldiko harrizko etxe berri haiek, Berrizen XVI. mendean datatu daitezkeenak, oso silarri berezia gorde dute, ondo ebakitako harlandua, luzexka. Askotan beranduagoko baserriek horma batean edo etxearen zatiren batean gorde dituzte hala jasotako hormak (Abaitua, Agirre, Agirregoitia, Agirresakona, Aretxaga, Arginzoniz, Arginzonizbeaskoa, Arroita, Basagutxia, Besoitagoena, Besoitaiturria, Bilbatuaganekoa, Deskarga, Isuntzadeskarga, Iturritzaga, Lasuenandikoa, Lebarietazpikoa, Matzaga, Matzagaganekoa, Olabarria, Olabeurigoena, Ortuguren, Otsaita, Sarriamatza, Sarriugarte, Zereintza eta Zugatza). Beste ezaugarri bat zera da: leiho gutxi, txikiak eta ordena handi barik zabalduta, kanpoko estetikari erreparatu barik. Sarritan leihoaren hegia molduratuta ageri da eta, taxutzeko, dintela darabilte.*

*Arria edo Lariz dira etxe trinkoen adibidea, dorretxe itxura ahaztu ez dutenak, nahiz eta Errenazimenduko landa jauregien antza ere izan. Arrakastatsuagoa da Besoitaormatxean aldarrikatzen den tipologia. Hiru gorpuzdun etxea da, erdian atartea daukana. Aldamenak harrizkoak ditu, aurreratuago, eta erdikoan, egurrezko dintelaren gainean, zurezko egitura, tarteak material arinagoekin beteta eta luzituta. Baserri honen fatxada nagusiko alde zaharrena -ikuslea aurrez aurre jarrita- eskumakoa da eta besteak balitekeurte batzuk beranduago jasotakoak izatea, era merkeagoan, harlandua bakarrik kantalak eta leiho ertzetarako utzita. Baserri hauetan horizontaltasuna da beste marka bat, oso etxe zabalak dira, gora nekez egiten dutenak.*

*Etxe tipologia hau guztiz errotuko zen Barroko bete-betean Berriz inguruan, batez ere XVII. mendetik aurrera, eta hurrengoan ere ikusiko dugu. Askotan dintelari eusteko erabilitako koloma klasikoan edo beste elementuren batean data jarriko zutenez, jakin dezakegu noiz egin ziren. XVII. mendean zehatz-mehatz dataturikoak dira Andikoaparizio eta Isuntza. Eta XVIII. mendekoak, Gangoitiena, Isuntzabekoa, Sarriugarte eta Ugartebidea.*

*Gainera, etxe mota hau oso aproposa zen lehenago egindakoa eraikin berrian integratzeko, Berrizbeitian gertatzen den moduan, 1572an datatzen baita harlandu ederraz egindako aldea. Bestea, ostera, harlangaitzezkoa da, kanaletako eta leiho ertzetako harlanduak ezik. Hauek izango dira aurrerantzean gehien erabiliko diren materialak harriaz dihardugunean.*

*Berrizbeitiakoa beste etxe batzuetan ere frogatu daiteke, maila apalagoan bada ere. Zeren alde bata harlanduekin errematatzen den moduan, bestaldean egurrezko zutoinak betetzen du haren zeregin tektonikoa zurezko dintelari eusterakoan. Badaude atartearen bi aldeak zurezko zutoinekin dauzkatenak, eta atartea oso zabala denean, beste zutiko batekin. Andikoaetxenagusia, Asola, Bilbatuaganekoa, Eizkoa, Otsaitabeitia, Olabelarrinaga, Ugalde eta Sarriurizar dira horien lekuko. Asurruti zaharrekoa, berriz, beste kasu bat da, berezia. Ezkerraldeko behealdea harrizkoa zuen, harrizkoa zen moduan egurrezko dintelari eusteko koloma, baina eskuma aldean, berriztatu baino lehen, egurrezko eta adreiluzko egitura lurreraino heltzen zen, ertzean ere ikaragarrizko zutoinarekin.*

*Berrizbeitiak eta inguruko beste batzuk beste bitxikeria bat daukate. Baserri askok dute adreilua lehenengo solairuko zurezko egiturako tarteak betetzeko, oso itxura koloretsua emanaz. Baina Berrizbeitian, Agirresakonan, Isuntzan, Isuntzabekoan, Isuntzagoikoan eta Matzagan zurezko egitura estalita dago adreilu grapatuekin, kolorearen sentsazioa areagotuz.*

*Aldi berean arkudun baserriak hedatu ziren, arku bakarra edo bikoitzekoak, puntu erdikoak edo beheratuak eta karpanel tankerakoak, beranduagokoetan. Atartea, dintelaz barik, arkuaz burutu zuten; eta gehienetan fatxadaren erdian, bera izanik baoak antolatzeko ardatza. XVII. mendearen amaieran hasi baziren egiten, XIX. mendean oraindik gustuko zituzten arkuak. Adibide bikainak daude Berrizko kofradia guztietan. Aitatzekotan, Abaitua, Andikoa, Arangurenazpikoa, Arboletanagusia, Arriaga, Arriagarrementeria, Arroitajauregi, Batarrita, Belakortu, Etxanoeta, Etxanoetaurre, Goikoerrota, Gomendio, Gomendiourrutia, Lazpitalarra, Loitzate, Matzaga, Matzagabekoa, Murgoitibeña, Oizgoikoa, Olabegoia, Olaldea, Ugartezabala, Uribetxenagusia, Uribeganekoa, Zabala eta Zubierrementaria. Azkenetarikoak arku biko sarrera egiten Gangutia, Urretxandikoa eta Zelaieta dira, XX. mende hasieran eraberrituak, Neoklasikoaren tankerara egin bazituzten ere.*

*XVIII. mendea azkena jotzen zegoenean, beste baserri eredu bat zabaltzen hasi zen. Neoklasikoaren arauei jarraituz, baserriek kaleko etxeen antza hartu zuten. Oso arrakastatsua izango zen tipologia eta XX. mendea hasi arte egin edo berritu ziren baserriak molde honen arabera eraiki ziren.*

*Atarte zabal handiak, dinteldunak zein arkudunak, desagertu egin ziren eta atea fatxadan bertan zabalduko zen. Etxeetan goranzko tendentzia nagusituko zen eta baoak handitu eta ugaritu egingo ziren, oso modu ordenatu eta*

*simetrikoan zabalduz fatxadan. Ia denak arkitrabatuak dira, nahiz eta arkudun baserri berantiar batzuk traza honetan eraiki. Harlandua kantaletan eta baoen ertzak burutzeko usatu zen eta hormetako material pobreagoak luzitu eta zuritu egingo ziren. Balkoiak ugaritzen hasi ziren, txikiagoak, lehenengo solairuan eta aldenik aldekoak, ganbarakoan. Baserri bihurtutako arnaga gehienak ere hala eraiki ziren. Eta ahalmen ekonomiko apalekoek egurra erabiliko zuten baoen dintelak egiteko.*

*Hasierako bat Bidebarrieta da, 1785ekoa, etxe txikia eta soila, baina iragartzen duena tendentziaren aldaketa. Baserri barroko zabal haiek alboratu egin ziren eta joera akademiko zorrotzaren aldeko apustua egin zuten, arrazionala, Neoklasizismoak zioenaren arabera. Baserri neoklasiko orijinalenak, gure ustez, Arangurenetxebarria eta Besoitaetxebarria dira, elkarren arteko lotura estilistiko bistakoa dutenak. Lehena 1851ekoa da eta fatxada nagusia, oso orekatua bada ere, modu asimetrikoan dauka antolatua. Atartea, arku beheratuduna, izkina batean dago eta lehenengo solairuan, egongelari dagokien baoetan, harlanduek bateratuta, harrizko mentsulek eutsitako balkoia du, burdinazko karelduna. Aldameneko fatxada batean, antzeko mentsulen gainean, komuna. Besoitaetxebarrian, ordea, fatxada nagusia sinplea da eta deigarriena bailarara ematen duen fatxada da, han baitago aldenik aldeko balkoia, teilatu hegalak babestuta, harrizko mentsulen gainean.*

*Hauez gain, baserri neoklasikoen zerrenda osatuko genuke ondorengoekin: Abaitua, Abaituetxebarria, Ametzualdekoa, Arboletatxikia, Armotxa, Atsategi zena, Batarritaetxebarria, Beñandikoa, Bolunbarri, Gangutia, Lazpitabekoa, Legorreta, Loitzatebarria, Murgoitiobeña, Oizerdikoa, Okagoikoa, Olabarrietxebarria, Pedrojuanena, Sarriortuzar, Ubillaganekoa, Uribeganekoa, Uribelebarieta eta Zelaieta.*

*XX. eta XXI. mendeetan ez da baserri berririk egin. Salbuespena Iturbeburu izan daiteke, txalet itxurakoa bada ere, jabeek nekazaritza dutelako ogibide. Beste baserri batzuk desagertu egin dira betiko eta landa eta zelaietan etxe berriak, txaletak ere eraiki dira, batzuk tradizioari jarraituz eta beste hainbat, zeharo molde berrian.*

*Hurrengo ataletan baserrien deskribapen xumea duzu, irakurle. Fatxada nagusiaren analisia izan da jarraitutako irizpidea, etxe nuklearraren fatxadarena hain zuzen. Ez ditugu kontuan izan beste gehigarri batzuk. Asko etxe zaharragoa zenaren aldeak dira, animalientzako edo beste zeregin batzuetarako utzitakoak, berria egin zenean. Eta beste batzuk, beranduago atxikitako gehigarriak. Eta ezker-eskumaz dihardugunean, ikusleak aurrean duenaren ikuspegia izan da araua.*

# Andikoa





# Abadetxea

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: **Abádetxie**



*43° 11' 9"* *2°35'29"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

XX. mende hasierako etxea da, bi solairu eta hiru ardatzetan antolatutako fatxadaduna, eredu klasikoen antzera. Baina hauetan egoten den simetria eta berdintasunaren aldeko gustua hautsi egiten dute fatxada nagusiko balkoiak eta azpialdera ematen duen fatxadako leiho luzeak. Hala ere, etxean aipatzekoak dira bao edo leihoen neurri ederra eta materialak. Eraikitzeko harlangaitza erabili zuten, juntura guztiak luzitu eta zurituta. Eta kontrastea eginaz, silarri bereziak usatu zituzten kantal eta baoen ertz guztietan, baita leihoen arku beheratuen dobeletan ere. Berezitasuna da silarrien akabera latza, leundu barikoa, inguruetan izan ezik.

toponimia

Abade, etxe *eta artikuluaz osatutako toponimoa. "Abadearen etxea" esan gura du eta izen generiko legez ere erabiltzen da ahoz. Izena arrunta eta ezaguna bada ere, ez da uste bezain "arrunta". Gutxi baitira,* lanbidea+etxe, *egitura duten etxe izenak, euskaraz ohikoagoa baita* Abadena *modukoak erabiltzea. Azken hau,* Abadena, *zaharragoa da eta 1704an ageri da Getxo eta Ibarrangelun, esaterako.* Abadetxea, *berriz XX. mendean egin zen arrunta Bizkaian. Dokumentazioan gaztelaniaz agertzen zaigu euskararen bazterkeriaren adierazgarri.*




# Agirre etxebizitza

Aldaerak: Agirrebeitia
Ahozkoa: Agérre



43° 11'20" 2° 34'51" Berriz Iruditan / A. Arbulu

*"... la casería titulada Aguirre... en la Cofradía de Andicona de la anteiglesia de Berriz, que se compone de dos viviendas, la una al Este con dos cocinas, dos cuartos portalados, zaguan, cuadra y bodega, con una prensa en piso llano, y de principal con dos cuartos, tres camarotes y el pajar, y la otra al Oeste de cocina, dos cuartos, cuadra portalada y zaguan en piso llano, y en el principal de un cuarto con dos camarotes y pajar; contiene una planta solar de ciento ochenta y seis estados..."*
*DJE, 7/ 119 or. (1903)*

Andikoa kofradian dagoen *Agirre* baserriaren gaineko lehen aipuak Bizkaiko su-erroldetan aurkitzen ditugu: *Aguirre* (1704). Hortik aurrera, dokumentu guztietan forma bera aurkituko dugu, XVIII. mendean zein XIX. eta XX. mendeetan, hots, *Aguirre* (1795, BAHP, A46/7), *Aguírre* (1859, BUA, Nmcr) eta *Aguirre* (1910, BUA, RU). Azken hamarkadetan, ahozko formaren eraginez, *Agérre* eta *Aguerre* (1967, BUA, CE) izenez jaso zen 1967ko Udal-erroldan. XIX. mendean ere, *Aguirreveitia* (1864, DJE, 1/ 65. or.) izenaz dokumentatzen da, seguruenik gertuko *Agirregoitia* (**Ikus Agirregoitia**) baserritik bereizteko. Arestian aipatu dugun moduan, *Agérre* da auzotarrek erabiltzen duten ahozko forma.

Aldi desberdinetan jasotako baserria da. Osteko fatxadan, esaterako, XVI. mende hasieran erabiltzen zen harlandua ikusi daiteke eta aurrekoan, ostera, XVIII. mende amaierako tankera bista bistakoa da, 1797ko data daukan inskripzioak ondo zehaztu moduan. Fatxada nagusian nabariak dira geroago erantsitako

## toponimia

Agirre *da euskal toponimoen artean hedatuena eta ia herri guztietan dugu* Agirre *izeneko etxeren bat. Mendebaldeen dagoen* Agirre *baserria Artzentales herrian dago eta ekialdeen Santa Garzin, Zuberoan. Honen zergatia erraz ulertzen da esangura baldin badakigu, "Agerian dagoena" izan ere* agirre *hitz hau* agertu *eta* ageri *hitzekin dago loturik. Ahoz arrunta da* Agerre *esatea baina mendez mendeko idazkera Bizkaian* Agirre *dugu. Ipar Euskal Herrian, berriz, ohikoa izan da* Agerre *eta handik sortu zen* Daguer *deitura. Deitura hori zuen batek asmatu zuen lehenengo argazkiak eta bere deituraren bidez dira ezagunak:* daguerrotipo.



Cofradia de Andicona.

1. La Casa de Aguirre de Juan de Aguirre, Viue en ella casa mayor.
1/2 Casa de Aguirregoytia de Margarita de Urquiola Viuda Vibe en ella, casa menor.
1/2 Casa de Andaconagoena de Fran.co de Andaconagoena Viue en ella, casa menor.
1. Casa de Andicona que llaman de Aparicio, de Juan de Andicona Viue en ella, y es casa mayor
1. Casa de Andicona de Dom.o de Larpita. Viue en ella casa mayor.
1/2 Casa de Ortu Zelayeta de Juan de Ogombe, y sus pertenecidos estan sin arrendatario, Casa menor.
1/2 Casa de Ortuguren de Mag.na de Ortuguren Viuda Viue en ella casa menor.
1. Casamayor de Andicona de D.n Juan Tiñz de Ugarte su Inclino Juan de Mumos Casa mayor.
1. Casa de Gangoytia de Mariana de Gangoytia, Viue en ella casa mayor.
1/2 Casa de Marien de Pedro de Marien, Viue en ella Casa menor.
1. Casa de Andicona Veytia de Pedro de Andicona Veytia Viue en ella, y es Casa mayor
1/2 Casa de Uribe Larrea de Pedro de Uribe Larrea, Viue en ella, Casa menor.
1/2 Casa de Ybarrieta de Juan de Yrunza, Viue en ella Juan de Uribe por Inclino, y es Casa menor.
1. Casa de Bilbatua Echabarria de Juan de Sanguti Viue en ella, y es casa mayor.
1. Casa de Bilbatua de suso de Juan de Bilbatua, Viue en ella, y es casa mayor.
1/2 Casa de Bilbatua de yuso de Pedro de Bilbatua, Viue en ella, Casa menor.
1/2 Casa de Alaga de Thomas de Zarria, su Inclina Ana de Mariel casa menor.
1/2 Casa de Alaga de Miguel de Ybarra, esta cayda, y sus tierras sin administrador media Casa.

*Bizkaiko su-erroldak, 1704.*

gorputza, terraza egiteko baliatua, eta beranduago zabaldutako leihoak. Guztia kontuan izanik, garaiko baserri tipikoa da, erdian daukan arku ederraren arabera antolatutakoa. Beheko solairuan leiho bana behintzat izango zituen albo banatan eta saietera bat ere badauka eskuma aldean. Goiko pisuan eta ganbaran, ostera, leihoak ageri dira. Eta sarrerako arku gainekoak balkoi bihurtutakoa dirudi. Harlangaitzaz jasotako etxea da, jatorriz luzituta egongo zena, harlandu ederra utziz arku, kantal eta leiho ertz guztietarako. Ganbara aldean egurrezko egitura bistan dauka, kontrastea eginaz zuri pintatutako horma enfoskatuekin. Bi isuritako teilatuak babestutakoa da eta hegal zabalari eusteko egurrezko besoak ditu.

# Agirregoitia (-a) etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Agérregóti



43° 11' 29" 2° 34' 53" Berriz Iruditan / J.A. Ramos

*"... la casería rústica titulada Aguirregoitia... situada en la barriada de Andicona jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende setenta y un estados superficiales de planta solar, y la que se compone de piso llano con zaguan, dos cocinas y cuadras, y de piso principal con cuatro cuartos y el pajar y de desban, siendo su construcción de paredes de mampostería por los cuatro costados, y las cerraduras del zaguan, angulos y los telares de las puertas y ventanas de piedra labrada..."*
*DJE, 2/ 23 or. (1866)*

Bizitza biko baserri honen gaineko lehen aipamenak, *Agirre* (**Ikus Agirre**) baserriaren garaikoak dira. Bizkaiko su-erroldetan 1704. urtean *Aguirregoitia* izena jasotzen da Andikoa kofradiaren baitan dagoen baserri-etxe bati erreferentzia egiteko. *Agirre* baserriarekin lotutako izena izango da honako hau, geografikoki haren goialdean kokaturik baitago. Dokumentu guztietan izena osorik agertzen da: *Aguirregoitia* (1825 , PE/1825) eta *Aguírre-góitia* (1859 BUA, Nmcr). Forma horixe bera mantendu da azken erroldetan ere: *Aguirregoiti* (1967, BUA, CE). Aurreko kasuan bezalaxe, hemen ere ahozko forma, hots, *Agérre*, abiapuntutzat hartuta *Agérregóti* osatu da. Elkarren ondoko etxe bik osatutako baserria da. Berriena eskumakoa da, zaharragoari kendutako zati bat aprobetxatuz jasoa. Eta etxe zaharrenean ere bi aldi, behintzat, antzeman daitezke. Lehenengo egindako etxeak leiho gutxi eta txikiak eta silarri luzenkak dauzka fatxadan XVI. mendean Berriz inguruan hain ohikoak zirenak. Mende bat beranduago, etxea handitu egin zuten. Guztiz eraldatuta ageri bada ere, horma berriak egin dituztelako, eredua XVII. mendean zabaldu zena da, hiru gorputzekoa. Aldamenetakoak, harrizkoak, euren kantal eta guzti, eta erdian, atarte zabala. Hain zabala ezen, egurrezko hiru zutoinen bidez antolatuta dagoela eta zurezko dintelen babesean. Hauen gain osoa egurrezko egituraz armatu zuten, tarteko harlangaitzezko hormekin. Leihoak lehen solairuan baino ez ditu. Teilatua bi isuritakoa da.

Horrelakoa da ere eskuma aldeko etxea, guztiz berriztatuta ageri dena. Harlangaitza erabili zuten hormetarako, baina harlandu ederra du kantaletan eta leiho guztien ertzetan. Hauek neurri onekoak dira, oso zaharrak ez direnaren seinale, ganbarako hormigoizko balkoia den moduan. Harri bateko inskripzio batek aldamenekoa jaso zeneko berri ematen digu, 1906, alegia.

toponimia

*Agirre (**Ikus Agirre**) baserriaren gaineko aldean dagoen baserria.*



# Aiagalde

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa:



*43° 10' 57"* *2° 35' 35"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*Aiaga* (**Ikus Aiaga**) izenez ezagutzen den parajean egin zen lehendabiziko etxea dugu honako hau, *Basagutxia* (**Ikus Basagutxia**) baserriaren lurretan.

XX. mendeko 70eko hamarkadan egin, eta 1990ean berriztatu zuten txalet hau. Luzitutako hormak ditu, atarte zabala aldamenean, eta erdian, ardatz gisa, goitik behera doan beirate kurbatua. Ezaugarririk bereziena leihoen jokoa da, modu bitxian zabalduta baitaude eta neurri desberdinetakoak baitira. Leihoetako batzuk benetan estuak dira, zutik zein etzanean kokatuta daude, eta moldura batek inguratzen ditu.

toponimia

*Euskal Herria osoan ditugu* Aia *osagaia duten leku izenak, ezagunean Ataungo auzoa eta Aia herri izena, eta Añibarrori esker dakigu esangura "aldatsa" dela. Kasu honetan* alde *hitzaz ageri zaigu lagunduta. Etxe izen berria da, baina ongi eratua dago Bizkaian ohikoa baita* alde *posposizioaz baliatzea.*

# Aiaga

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa:



*43° 10' 57"* *2° 35' 41"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*Aiagalde* (**Ikus Aiagalde**) eraiki eta urte batzuetara, 1982an, eraikitako bizitza biko txaleta dugu. Hasieratik parajearen izena hartu zuen: *Aiaga*. *Gangutienazpikoa* (**Ikus Gangutienazpikoa**) baserriaren lurretan eraiki zuten.

XX. mendeko 80ko hamarkadan egindako bizitza biko txaleta da. Guztiz modu simetrikoan eratutako fatxada bat dauka, isurki biko teilatuaren azpian. Sarrerako atarteak erdialdean daude, guztiz bereizita. Horien aldamenetara, leiho txiki bat eta lurreraino doan leiho luze eta zabal bat dauzka. Lehenengo solairuan, leiho luzeak daude lerrokatuta, eta erdialdean, zertxobait aurreratuta, begiratoki bana eta balkoia. Ganbara aldean, teilatuaren formara egokitutako leihoak ditu. Luzitutako hormen kontrapuntua egur ilunezko pertsianek egiten dute.

toponimia

*Euskal Herria osoan ditugu* Aia *osagaia duten leku izenak, ezagunean Ataungo auzoa, eta Añibarrori esker dakigu esangura "aldatsa" dela. Kasu honetan leku adiera duen* aga *atzizkiaz lagunduta ageri da*



# Aiagaurre

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa:



*43° 10' 55"* *2° 35' 37"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*Aiaga* (**Ikus Aiaga**) inguruan eraikitako bizitza biko azken txaleta, 1996. urtean. Orain arte izenik gabe zegoen txaleta da honako hau, toponimia lana egiterakoan, *Aiaga* txaletaren aurrealdean egonda, *Aiagaurre* izena hartzea proposatu eta onartu zen.

Guztiz simetrikoa da, eta bi isurkitako teilatuaren ardatzaren arabera antolatuta dauka fatxada nagusia. Sarrerako atarteak arku beheratuak ditu, beheko solairuan daude, eta etxebizitza bakoitzaren erdialdean eta alboetan leiho bana dute. Goiko pisuetan, berriz, etxearen erdialdea nabarmentzen da. Lehenen solairuan, etxebizitza bakoitzean eraikitako balkoi sakon eta handia dugu elementu azpimarragarri. Ganbara aldean, hormarako adreilua erabili zuten alde hori indartzeko, eta lau leihotxo ere baditu. Etxea luzituta dago, eta egurra da, adreiluarekin batera, kontrasterako erabili dutena; hala, zurezko pertsianetan eta egur-imitazioz egiturak ditugu, lehenengo solairuan bereziki, etxe zaharragoen estiloan.

toponimia

*Euskal Herria osoan ditugu Aia osagaia duten leku izenak, ezagunean Ataungo auzoa, eta Añibarrori esker dakigu esangura "aldatsa" dela. Aiaga baserriaren aurrean eraikitako etxea dugu izenak berak dioen bezala.*





# Aiagape

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa:



43° 10' 57" 2° 35' 44" Berriz Iruditan / J.A. Ramos

*Aiaga* (**Ikus Aiaga**) txaletaren azpialdean 1980ko hamarkadan eraikitako etxea dugu. Orain arte izenik gabe zegoen, toponimia jasotzeko lana egiterakoan, haren kokapenari erreparatuta *Aiagape* izena proposatu zen, eta jabeek onartu.

Eraikin berria da, L formako oinplanoaren gainean jasoa, eta alderik motzena egungo etxe modernoetan aurkitu ohi ditugun garaje eta bestelako erabileretarako utzi dute. Solairu bakarreko etxea da, eta teilatupe bat ere badu, alboko fatxadako leiho poligonalak eta teilatuko txapitularen bidez argitzen dena. Hormak luzituta dauzka, baina leihoen eta baoen kolore ilunak uniformetasuna hausten du.

toponimia

*Euskal Herria osoan ditugu Aia osagaia duten leku izenak, ezagunean Ataungo auzoa, eta Añibarrori esker dakigu esangura "aldatsa" dela. Kasu honetan behe hitzaren aldaera den be-z ageri zaigu lagunduta, "beheko Aiaga".*



# Andikoa baserriak



*Berriz Iruditan / T. Angoitia*

**Andikoako Andra Maria** ermitaren inguruan sortutako etxe multzoa dugu izen bereko kofradian aurkitzen ditugun etxe hauek: **Andikoa, Andikoabeitia, Andikoagoitia, Andikoaetxenagusia, Andikoaparizio** eta **Andikoagoena**.

toponimia

*Euskal fonetikaren ezaugarrietako bat bokalen artean zeuden* -n-*ren desagertzea izan da. Antzina* n *mota bi zeuden euskaraz, gogorra, sarritan nn idazten zena (*Enneco*) eta leuna, baina leuna desagertu egin zen. Hau orain dela mila urte baino gehiago, batzuen ustez orain dela 1.500 urte, izan zen eta horregatik latineko* catena*, arena edo* canpana *hitzak* katea, harea *eta* kanpai *bihurtu ziren. Euskal hitzek ere galdu zuten* n *hori adibidez* gaztana *eta* ardano *hitzetatik gazta eta* ardoa *sortu ziren. Hitz konposatuetan, berriz badugu* n *horren oroitzapena eta* katenbegi, kanpandorre, gaztanbera *edo* ardantza *esaten dugu. Leku izenetan ere gertatu zen eta* Etxano *modukoek jatorrizko* nn *gorde zuten bitartean,* n *bihurtuta, besteek galdu eta* Galdakao, Lemoa, Lazkao *eta abar bihurtu ziren. Adituen ustez* -ano *amaiera dugun kasuetan aurrena pertsona izena dugu jabetza adierazten zuelako.*

*Behin baino gehiagotan esan dugun legez, Bizkaian ohikoa da etxe izenetan auzoa izena, jatorriz etxe baten izena zena, beste ezaugarri bereizgarri batez lagunduta agertzea. Kasu honetan,* **Andikoabeitia** *Andikoa auzoko beheko etxea da.* Beiti *ez da gaur egun erabiltzen baina ohikoa da deitura eta etxe izenetan.* **Andikoaetxenagusia** *baserriari dagokionez, izenaren bigarren osagaiak erakusten du Andikoa auzoko etxe nagusia dela, ez dakigu zaharrena ala ez.* **Andikoagoena** *aldiz, Andikoa auzoko goien dagoen etxea lirateke.* **Andikoagoitia** *auzoko goiko etxea zen* goena *eraiki zuten arte.* Goiti, beiti *bezala, ez da gaur egun erabiltzen baina ohikoa da deitura eta etxe izenetan.* **Andikoaparizio***, Andikoa auzoko etxe honek* Aparizio *izen hartu zuen 1740an. Geroago beste izen batzuk ere* Saidxúena *edo* Pastóriena *hartu zituen.*

# Andikoa

etxebizitza

Aldaerak: Arnaga
Ahozkoa: Andíkoa



*43° 11' 8"* *2° 35' 31"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*"... la casa llamada de Arnaga-andiconabeitia, sita con sus pertenecidos en termino jurisdiccional de la Anteiglesia de Berriz... ocupa una planta solar de cuarenta y siete estados cuadrados, se compone de su piso llano que consta de zaguan, cocina, aposento con alcoba y cuadra, y en el resto desvan y pajar... sus pertenecidos que son; una casa accesoria sita frente a la principal... y la que ocupa una superficie de doce y medio estados, hallándose distribuida en cuadra y desvan..."*
*DJE, 3/ 165 or. (1877)*

Bizitza bakarreko baserri honen gaineko lehen aipua 1704an aurkitzen dugu, Bizkaiko su-erroldetan: *Andicona*. Izen hori mantentzen da 1859ko Udal-izendegian ere; baina, hortik aurrera, *Arnaga* moduan agertzen zaigu dokumentazioan. Egun, auzotarren artean eta batez ere inguruan bizi direnen artean, *Arnaia* izenez ezagutzen da. Andikoako Goierrin (elizatik gora), berriz, *Andikoa* izenez ezagutzen dute baserri hau.

Izenak adierazten duenez, baserri bihurtutako arnaga da, XIX. mende hasieran, 1822an hain zuzen, nahiz eta beranduago pisu bat jaso zioten gaur daukan itxura hartuz. Baoak lau ardatzen arabera antolatu zizkioten eta atartea, arku ederrekoa, eskuma aldeko erdiko ardatzean dauka. Leihoak lau ardatzok ezarritako antolamenduaz ordenatuta dauzkan arren, lehenengo solairuko berdintasuna harrizko zorua duen balkoi batek hausten du. Bestalde, bigarren solairuan erdiko bi leiho luzeak aldenik aldeko zurezko balkoiak lotzen ditu, beste baserri askotan legez. Isuri biko teilatua du eta forma aprobetxatuz, hiru leihotxo ditu goikaldean, erdian eta izkinetan. Luzitutako hormak ditu eta kantal eta ertz guztietako harlanduaren kolore gorrixkak izugarrizko bizitasuna ematen dio etxeari.



# Andikoabeitia (-a) etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: **Andíkoabéiti**

*"... la casería rústica titulada Andiconabeitia, radicante en la anteiglesia de Berriz, en el barrio de Andicona... consta de piso llano con zaguan de entrada, cocina y cuadras, y de piso principal con dos cuartos y el resto pajar y camarote y mide su planta solar ciento sesenta y dos metros y setenta y siete decímetros cuadrados... "*
*DJE, 6/ 92 or. (1892)*



*43° 11' 10"* *2° 35' 32"* *Berriz Iruditan / T. Angoitia*

Bizkaiko lehen su-erroldan agertzen da *Andikoabeitia* baserriaren gaineko lehen aipamena, *Andicona Ueytia* (1704). Hortik aurrera, dokumentuetan izen bera mantentzen da, aldaera batzuekin, besteak beste -*v* edo -*b* idaztean izenaren bigarren osagaia: *Andicona Veitia* (1825, PE/1825), *Andiconabeitia* (1857, BUA, Viv), *Andiconaveitia* (1866, DJE, 2/ 27. or.) eta *Andicona beitia* (1939, BUA, 37). Auzotarren artean *Andíkoabéiti* forma erabiltzen da euren arteko ahozko komunikazioan.

XX. mendeko 80. hamarkadan izugarrizko aldaketa eman bazioten ere, mantentzen du oraindik jatorrizko etxearen itxura. Izan ere, beheko solairuko silarrien kalitatea ikusita, XVI. mendeko eraikin baten aurrean gaudenaren zalantzarik ez dago, baita puntu erdiko leiho bikiari erreparatzen badiogu ere. Hiru gorputzez osatutako eraikina da eta erdian egurrezko dintelak gordetako atartea dauka, harkantoiek eutsia. Gainean, XVII. mendetik aurrera sarritan ikusi dugun adreilua.





# Andikoaetxenagusia (-a) etxebizitza

Aldaerak: Etxenagusia
Ahozkoa: Etxénaudxidxe



*"... la casería rústica titulada de Andicona echenausia... situada en el barrio de Andicona de la Anteiglesia de Berriz, y la que se compone de un piso y desban con sus correspondientes cuadras y habitaciones, y la que comprende una cabida total ó de area superficial de diez mil estados de labor, que están dentro de un perímetro..."*
*DJE, 1/ 139 or. (1863)*

*43° 11' 17"* *2° 35' 18"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Andikoako bi etxe multzo nagusien artean kokatzen den baserri honen gainean dugun lehen aipu dokumentala 1825eko polizia-erroldan aurkitzen dugu, *Andicona Echenagusia*. Izenaren bigarren osagaiari dagokionez, aldaketa nabarmen batzuk jasotzen dira dokumentazioan, eta batzuetan *"etxenagusia"* aurkitzen dugun bitartean, besteetan *"mayor"* gisa jasotzen da: *Andicona-mayor* (1857, BUA, Viv), *Andicona Echenaucia* (1867, JCR 2908/008) eta *Andicona Echenausia* (1939, BUA, 37). XX. mendeko azken erroldan, aldiz, *Echenagusi* (1967, BUA, CE) era jasotzen da. Auzotarren artean, etxe hau *Etxénaudxidxe* moduan ezagutzen da.

Berriz aldean XVII. mendean finkatutako baserri eredua da, nahiz eta sasoi desberdinetan hainbat aldaketa jasan duen. Hiru gorputzez osatutakoa da, harrizkoak izanik beheko solairuko aldamenekoak eta erdian, oso atarte zabalekoa. Horregatik, egurrezko dintelari eusteko, zutikoa dauka harrizko oinaren gainean, ia antzeman ere ez dena egiten, harlangaitzezko horma bat egin dutelako atarte erdi aprobetxatzeko. Gorengo pisua eta ganbara egurrezko egituraz burututakoak dira, itzelezko zutoinekin, eta tarteak, adreiluzkoak. Eskuma aldeko gorputza harrizkoa da dena. Beheko solairuko leiho orijinalak harlanduzkoak dira, etxearen kantalak moduan. Besteak, egurrezkoak eta enfoskatuak. Bi isuritako teilatua dauka.



# Andikoagoena (-a) etxebizitza

Aldaerak: Gonengoa
Ahozkoa: Andikoagonengóa / Gónengue

*"... un caserio llamado Andicona-goenengoa, en termino de la anteiglesia de Berriz... ocupa una planta solar de setenta y cuatro estados ó sean doscientos ochenta y un metros..."*
*DJE, 5/ 231 or. (1887)*



*43° 11' 28"* *2° 35' 10"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Izenak adierazten duen moduan, Andikoa etxe multzoaren punturik gorenean dago kokatuta baserri hau, XVI. mendetik gutxienez. *Andikoaparizio* (**Ikus Andikoaparizio**) eta *Andikoagoitia* (**Ikus Andikoagoitia**) baserrien atzealdean dagoen etxe honen gaineko lehen aipuak Bizkaiko su-erroldetan aurkitzen ditugu: *Andiconagoena* (1704) eta *Andicona Guena*. XIX. mende erdialdera arte, *Andiconagoena* (1857, BUA, Viv) forma da nagusi, eta orduz geroztik, *Goenengoa* (1866, DJE, 2/ 20. or.) eta *Andicona-goenengoa* (1887, DJE, 5/ 231. or.) bezalako erak agertzen dira. 1967an, Udalak egindako eraikin-erroldan *Gonengoa* (BUA, CE) izenez agertzen da erregistratuta, zalantza barik *Gónengue* ahozko formaren eraginez. Berriztarrek *Andikoagonengóa* eta *Gónengue* formak erabiltzen dituzte.

Baserriak XVI. mendeko horma bat gordetzen du, silarriek erakusten duten bezala. Estua eta luzea da, bi horma paraleloen artean egindakoa, eta aldatsari egokitua. Fatxada oso sinplea du, luzitua eta pintatua. Bi pisuak nabarmentzekoak dira. Hala, behean, ate bi bereiz daitezke, eta goikoan, leiho txiki bat eta hormigoizko balkoia, bi besok eutsia. Isurki biko teilatua dauka, hegal zabalekoa, eta horri eusteko ere, besoak ditu lagungarri.





# Andikoagoitia (-a) etxebizitza

Aldaerak: Estebanena
Ahozkoa: Andikoagóítia / Estébanekue



*"... la casería denominada Andiconagoitia... sita en la Cofradía de Andicona de la anteiglesia de Berriz, se compone de dos viviendas con un piso bajo y otro alto con sus zaguanes, cuadras y pajares, ocupando con inclusión de un retazo de huerta doscientos cinco y medio estados..."*
*DJE 6/228 or. (1897)*

*43° 11' 26"* *2° 35' 12"* *Berriz Iruditan / T. Angoitia*

Bizitza biko baserri honek *Andikoaparizio* (**Ikus Andikoaparizio**) baserriaren ondoan kokatzen da, eta jatorrian ugazaba berarenak ziren eraikin biak. 1729ko dokumentuetan, *Andicona Goitia* (BAHP, A486/32) baserriaren berri dugu, eta urte batzuk geroago, Bizkaiko su-erroldetan ere aurkituko dugu, forma bera mantenduta: *Andicona Goitia* (1745). XVIII. mende amaieran, lehendabizikoz *Andiconagoitia Estevanena* (1796, BAHP, A82/7) moduan agertzen da. Hortik aurrera, aldaera desberdinak jasoko dira dokumentazioan, eta batzuetan *Estevanena* (1825, PE/1825), *Estebancoa* (1863, DJE, 1/ 39. or.) eta *Andiconagoitia Estebania* (1905, BUA, 40) aurkitzen dugun bitartean, beste batzuetan *Andicóna-góitia* (1859, BUA, Nmcr) eta *Andicona-Goitia* (1910, BUA, RU) gisa dokumentatzen da. XX. mendearen bigarren erdian, aldiz, *Estebanecua* forma aurkituko dugu, ahozko erabileraren ondorioz (adibidez, 1967ko Udal-erroldan). Esan bezala, berriztarren artean gehien erabiltzen diren formak *Andikoagóítia* eta *Estébanekue* dira.

Baserri etxe handia, bizitza bikoa. XVI. mendeko etxearen zati garrantzitsuak gordetzen ditu, kalitate oneko silarriekin egindako hormek edo hegi molduratua daukan fatxada nagusiko leihoak adierazi moduan. Alde honetan arku eder batek markatzen du erdia eta berau antolatzen lagundu. Izan ere, leihoak ez ditu oso era ordenatuan zabalduta, arkuaren gaineko biak izan ezik, eta ganbaran zurezko balkoia dauka. Beste askotan gertatzen den eran, Errenazimenduko etxea handitu egin zuten eta XVIII. mende bukaeran fatxada berria atondu arku ederrarekin, eta beste gorputz bat gehitu aldamenean. Harlangaitza erabili bazuten ere, kalitate onekoa izan zen, kantal eta baoen harlanduzko ertzak bezala. XX. mendeko 30. hamarkadan ere berriro itxuratu zuten. Teilatua isuri bikoa dauka.



# Andikoaparizio etxebizitza

Aldaerak: Aparizio / Sayuena
Ahozkoa: Aparício / Saidxúena / Pastóriena



*43° 11' 27"* *2° 35' 10"* *Berriz Iruditan / T. Angoitia*

Baserri honen jatorria XVI. mendean kokatzen den arren, Bizkaiko su-erroldetan aurkitu ditugu lehendabiziko aipuak: *Aparicio* (1704) eta *Andicona Aparicio* (1745). XIX. mendean, *Andiconagoitia Aparicio* (1826, BAHP, A282/15) mantentzen da, eta hori aurkituko dugu ia dokumentu guztietan, nahiz eta XX. mendeko zenbait dokumentutan bakarrik *Aparicio* (1967, BUA, CE) agertu. Andikoatarren, eta, oro har, berriztarren artean, *Saidxúena* edo *Pastóriena* moduan ezagutu izan da baserri hau. Ezer gutxi dakigu *Saidxúena* izengoitiaren gainean, dokumentazioan behin baino agertzen ez delako: *Aparecio Zañuenia* (1905, BUA, 40).

Baserri-etxe handia da, bizitza bikoa. Inguruko beste etxe batzuen antzera, XVI. mendeko horma ederra gorde du, silarri tipikoekin altxatua, eta bertako leiho baten moldura eta puntu erdiko sarrera-arkua ere mantendu dira. Hala ere, gaur bere osotasunean daukan itxura, XVII. mendean nagusitu zen estilokoa da, hau da: harrizko bi gorputz alboetan eta erdian, barrurago atarte zabala duen beste bat, eta, gainean, egurrezko egitura, adreiluzko hormekin tartean. Aldamenetako gorputzak harlangaitzez eginda daude, nahiz eta kantalak eta leiho-ertzak harlanduzkoak izan. Atarteari dagokionez, esan beharra dago obrak egin direla oraintsu, baina bistan dauka jatorrizko dotorezia. Izan ere, Berrizko beste baserri batzuetan legez, toskanar koloma erabili zuten dintelari eusteko, eta bertan, orduko data du inskribatuta: *"1698 AÑO"*. Teilatua bi isurkitakoa da.

# Andikoako Andra Mari ermita

Aldaerak: Elizalde
Ahozkoa: Elíxalde



*43° 11' 10"* *2° 35' 29"* *Berriz Iruditan / T. Angoitia*

Andikoako kofradiako ermita Ama Birjinari eskainia da. Eraikin bikaina da eta bere neurri itzelak parrokia baten antza ematen dio, ermita gehienak baino handiagoa da eta. Harlandu ederraz jaso zuten, XVI. mende hasierako estilo gotikoan. Euskal Herrian orduan egiten zen legez, gurutze ganga konplexuez estali zituzten dauzkan hiru tramuak. Eta barruak argitzeko, idi-begi biribilak eta leihoak usatu zituzten, batzuk zorrotzak eta beste batzuk, puntu erdikoak. Sarrerako arkua ere halakoa da, arku ojibalduna.

Oinaldeko korua, berriz, beranduagokoa da, 1598ko inskripzioak argitu bezala, eta oso interesgarria. Beste ermita gehienetan egurra erabiltzen bada ere, Andikoakoa harrizkoa da, eta lotura estilistiko zuzena dauka parrokiako koruarekin.

Ondoren gehitu zizkioten sakristia, kanpai-horma eta hegoaldera duen elizpea ere. Andabidea ere gordetzen du oraindik.



# Asola

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Ásóla

*"... la casería titulada Asola y sus pertenecidos radicantes en jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz... en la Cofradía de Andicona que se compone de dos viviendas en piso bajo y alto, ocupa con inclusión de su arnaga, zaguan, horno y la huerta una superficie de ciento treinta estados, o cuatro areas y cuarenta y cinco centiareas..."*
*DJE 3/154 or. (1877)*



*43° 10' 45"* *2° 35' 18"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Baserri honen gaineko lehen arrasto dokumentala Bizkaiko su-erroldetan aurki-tzen dugu, 1704. urtean: *Asola*. Hortik aurrera dokumentazioan aldaketa gutxi jasan ditu izen honek, gehienetan *s* hizkiaz idatzia agertuko da, eta beste batzuetan *z* hizkiaz.

Bizitza biko baserria da. Oso aldatuta dagoen arren, bistan dauka Berriz inguruan XVII. mendean hain hedatuta egon zen tankerakoa dela, hiru gorputzez osatutakoa. Aldamenetako gorputzetan, beheko solairuan, harria erabili zuten hormak egiteko eta erdikoan, atartea egin zuten, egurrezko dintelak babestua. Hain da zabala, zutikoa daukala erdian. *Andikoaetxenagusian* (**Ikus Andikoaetxeanagusia**) bezala, erdialdeko gorpu-tzaren egitura egurrezkoa da, lurrerainoko zutoinekin alboetan, eta tarteetan adreilua usatu zuten. Etxearen kantalak harlanduzkoak dira eta hainbat horma luzitu eta pintatuta ageri dira.

toponimia

*Ez dakigu zein den izen honen jatorria. Pentsatzekoa da honen atzean Asua toponimoa egotea eta "Asuaren ola" izatea, baina ezin da beste azalpenik alde batera utzi. Adibidez pentsa genezake asuri "bildots" hitza egon litekeela. Dena dela, bigarren azalpen honek ez gaitu betetzen. Ola hitzak bi adiera izan ditu euskaraz "kortabaso", erdaraz "sel", herri basoetan egiten ziren lur-hesi bereziak, itxura biribila zutenak, eta geroago gaur egungoa, burdina lantzeko lekua.*

# Basagutxia (-a) etxebizitza

Aldaerak: Basagutxiganekoa / Basagutxigoikoa
Ahozkoa: Basóitxi



43° 10' 58" 2° 35' 23" Berriz Iruditan / T. Angoitia

*"... una caseria llamada Basaguchiganecoa... en la cofradía o barriada de Andicona de la anteiglesia de Berriz, es de dos viviendas y se compone de piso bajo con portalada, y principal; ocupa con la planta del horno noventa y tres y medio estados, equivalentes a tres areas y cincuenta y seis centiareas..." DJE 5/163 or. (1886)*

Baserri honen gaineko lehen aipuak XVII. mendean aurkitzen ditugu: *Vassaguchia* eta *Bassaguchia* (1650, JCR 0763/016). Bizkaiko suerroldetan ere, haren berri topatu dugu; baina, kasu horietan, *Basaguchia de Suso* (1704) aipua aurkitzen dugu, azpiko edo aurreko aldean dagoen *Basagutxibeaskoa* baserritik (**Ikus Basagutxibeaskoa**) bereizteko. 1825ean egindako polizia-erroldan *Basaguchia ganecoa* (PE/1825) aurkitzen dugun bitartean, 1859an Udalak eginiko izendegian *Basaguchías* moduan agertzen dira baserri hau eta horren ondoan dauden *Basagutxibeaskoa* eta *Basagutxietxebarria* (**Ikus Basagutxietxebarria**). XIX. mendearen bigarren erditik aurrera, dokumentu gehienetan *Basaguchiganecoa* (1886, DJE, 5/ 163. or.) eta *Basaguchi Ganecua* (1905, BUA, 40) erak nagusitzen dira. Auzotarren artean, *Basóitxi* forma da erabiliena ahozko komunikazioan.

Argazkian ikusten den baserria gaur egun ez dago bere horretan. Berriztatze prozesuaren ondorioz, behealdeko harrizko gorputzak baino ez dituzte gorde. Hala ere, kontserbatzen ditu baserri zaharraren hainbat elementu. Hasteko, etxearen tankera, hainbatetan aipatu dugun hiru gorpuzduna. Erdian, egurrezko dinteldun atarte zabala. Eta aldamenetan, ohiko harrizko gorputzak. Bereziena, XVI. mendeko hormak gordetzea da, silarri luzenkak erabilita, eta leihoen moldurak ere bai. Beste horma guztiak ere harrizkoak dira, harlanduzkoak izanik kantal eta leihoen ertzak.

toponimia

*Izen hau gaur egun sortuko bagenu* Basotxikia *esango genuke Gutxi garai batean txiki esateko erabiltzen baitzen. Araban, esaterako, Miñano Menor herriaren euskal izena Miñaogutxi da. Hitz konposatuetan, euskaraz, ohikoa da* -o>-a *aldatzea (*pagadi, basakatu...*) eta horregatik ageri da* basa.



# Basagutxibeaskoa (-a) etxebizitza

Aldaerak: Beaskoa
Ahozkoa: Bíxketxe / Bíxko

*"... la casería y pertenecidos de Basaguchiveazcoa radicante en la Cofradía de Andicona en la anteiglesia de Berriz... se compone de piso bajo y en él, cocina, dos cuartos y cuadra; de habitación con dos cuartos, pajares y camarotes ocupa con inclusión de la Arnaga o accesoria, una campa libre y la huerta cuatrocientos setenta y siete estados equivalentes a diez y ocho areas, quince centiareas,... "*
*DJE 3/151 or. (1877)*



*43° 10' 57"* *2° 35' 22"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Baserri honen gaineko lehen aipu dokumentala 1716an aurkitzen dugu: *Basaguchi Veazcoa* (BAHP, A1794/32). 1745eko Bizkaiko suerroldetan *Basaguchea de Iuso* aurkitzen dugu, eta XIX. mendean zehar ere, izen bera aurkituko dugu, 1825eko polizia-errolda kasu: *Basaguchi Veazcoa* (PE/1825). Auzokideen artean, *Bíxketxe* edo *Bíxko* erabiltzen dira, eta *Beaskoa* baserria izenez ere ezagutzen da Andikoa aldean. Berez, 1967an Udalak egindako eraikin-erroldan *Biesco* (BUA, CE) agertzen da.

Bizitza biko baserria da, fatxadan bertan ondo baino hobeto igartzen den moduan, guztiz era simetriko eta garbian baitago antolatuta. Solairu bi eta teilatupekoaz osatuta dago eta bao guztiak lau ardatzen arabera zabaldu ziren, beheko solairuko sarrerako ateak ezik, leihoen artean daudelako. Behekoekin lerrokatuta, lehenengo solairuko leihoak daude, teilatupeko leiho luzeak eta izkinako leihotxoak, baita gorengokoak ere. Batasuna emateko eta bertikaltasuna hausteko, zurezko balkoia dauka aldenik alde, goiko pisuan. Harlangaitza erabili zuten eraikitzeko, kantaletan eta bao guztien ertzetan ezik, hauek harlanduaz egin zituztelako. XIX. mende amaierako edo XX. mende hasierako baserria da.

toponimia

*Maiz esan dugun legez Bizkaian ohikoa da etxe berriak elkarren ondoan eraikitzea eta ondorioz jatorria etxe izena zela auzo izen bihurtu eta horko etxe izen guztietan ageri da. Kasu honetan beasko hitzak "behekoa" dela esan nahi du. Beaskoa hitzaren osagaiak beko eta indarra ematen zuen as osagaia bide dira. Esan bezala, izen hau gaur egun sortuko bagenu Basotxikia esango genuke gutxi garai batean txiki esateko erabiltzen baitzen. Araban, esaterako, Miñano Menor herriaren euskal izena Miñaogutxi da. Hitz konposatuetan, euskaraz, ohikoa da -o>-a aldatzea (pagadi, basakatu...) eta horregatik ageri da basa.*

# Basagutxietxebarria (-a) etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Etxébarri



43° 10' 57" 2° 35' 24" Berriz Irudita n / J.A. Ramos

*"... una casa denominada Basaguchi-Echevarria... en Andicona del barrio del Oeste de la anteiglesia de Berriz se compone de piso llano de zaguan, cocina y dos cuartos: en el piso llano de un cuarto y en el superior camarote y en resto del alto en bajo cuadra pajar... mide su planta ciento noventa y siete metros cuadrados..."*
*DJE 6/79 or. (1891)*

*Basagutxi* etxeen artean berriena da honako hau, eta XVIII. mende erdialdean dugu honen berri lehenbizikoz, Bizkaiko su-erroldetan *Basaguchea Echevarria* (1745) ageri baita. Izenaren bigarren osagaiak adierazten duen moduan, etxe berria da. Aldaera gutxi jasan ditu izenak dokumentazioan, eta beti forma bera mantendu du: *Basaguchi-Echebarria* (1840, BAHP, A334/19) eta *Basaguchi-Echevarria* (1891, DJE, 6/ 79. or.). Salbuespen moduan, arestian aipatutako Nomenclatorra dugu, bertan *Basaguchías* (1859) moduan izendatzen baitira zonalde honetako baserri-etxeak. Ahozkotasunean, berriztarren artean *Etxébarri* forma da gehien erabiltzen dena baserrietxe hau identifikatzeko.

Baserri bitxia, harrizko horma biren artean eraikitakoa, Bizkaiko erdialdean eta mendebaldean gehiago ikusten den trazan. Fatxada nagusian, beheko solairuan harrizko gorputz bakarra dauka ezkerraldean eta beste guztia, atarte zabal batek hartzen du. Hau zurezko dinteldunа da eta, eusteko, harrizko pilarea dauka alde batean, erdian barik. Gaineko guztia egurrezko egituraz egin zen eta tarteak luzitu eta pintatuta daude. Harriaren tratamendua ohikoa da, harlandua, ertz danetan eta harlangaitza, gainerakoetan. Fatxada nagusiko harrizko leiho bakarrak hegi molduratua dauka. Teilatua bi isuritakoa da, miru buztana gehitu bazioten ere. XVIII. mende hasieran eraikiko zuten.

toponimia

*Maiz esan dugun legez Bizkaian ohikoa da etxe berriak elkarren ondoan eraikitzea eta ondorioz jatorria etxe izena zela auzo izen bihurtu eta horko etxe izen guztietan ageri da. Kasu honetan etxe berria besterik ez. Holakoetan ohikoa da ahoz bigarren zatia besterik ez erabiltzea "Etxebarri" eta izen osoa bakar bakarrik erabiltzea nahasteko aukera dagoenean. Esan bezala, izen hau gaur egun sortuko bagenu* Basotxikia *esango genuke gutxi garai batean txiki esateko erabiltzen baitzen. Araban, esaterako, Miñano Menor herriaren euskal izena Miñaogutxi da. Hitz konposatuetan, euskaraz, ohikoa da* -o>-a *aldatzea (*pagadi, basakatu...*) eta horregatik ageri da* basa*.*



# Bilbatua (-a)

etxebizitza

Aldaerak: Bilbatuetxebarria
Ahozkoa: Bilbétu

*"... la casería rústica titulada Bilbatua Echevarria... y su casa accesoria llamada Bilbatuaganecoa... situadas en la barriada de Andicona jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprenden con sus zaguanes, horno, huerta y heredad contiguas quinientos setenta y nueve estados cuadrados superficiales de cabida, y se compone cada una de ellas de una vivienda, con piso bajo a manera de entresuelo y piso alto..." DJE 2/32 or. (1866)*



*43° 10' 50"* *2° 35' 41"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*Ereñaga* baserritik Andikoako elizara doan bidean aurkitzen ditugu *Bilbatua* baserriak (**Ikus Bilbatuaganekoa** eta **Bilbatuazpikoa**), eta tartean, honako hau: *Bilbatua* (1686, BAHP, A859/30). XVII. mendetik aurrera aurkitzen ditugu baserri honen gaineko aipuak, nahiz eta XVIII. mendeaz geroztik *Bilbatua Echabarria* eta *Vilbatua Echebarria* (1704 eta 1796, Bizkaiko su-erroldak) moduan agertzen den, bai Bizkaiko su-erroldetan eta baita garaiko beste dokumentuetan ere, esaterako: *Bilbatua Echebarria* (1817, BAHP, A268/13) eta *Bilbatuaechevarria* (1857, BUA, Viv). 1825eko polizia-erroldan, aldiz, *Bilbatua* (1825, PE/1825) agertzen zaigu, eta 1859ko izendegian *Bilbátuas* moduan agertzen da, izen bereko baserriak batuz. Auzotarren artean, *Bilbétu* izan da formarik erabiliena, *Bilbatuetxebarria* izena baztertuta gelditu delarik.

Bi isuritako teilatudun baserria da, inongo simetriarik ez duena, alde bata bestea baino handiagoa delako, noizbait ezkerraldeko gorputza gehitu ziotelako. Fatxada nagusian deigarria da atarte zabal-zabala, egurrezko dintelduna, eta eskuma aldeko gorputza, bestea baino estuagoa. Behealdea harrizkoa bada ere, lehenengo solairua eta ganbara aldea luzitu eta pintatuta daude. Eta baoei erreparatzen badiegu, leihoak dira nagusi, teilatupeko zurezko balkoia izan ezik. Aldi desberdinetan egindako baserri etxea da, zenbait arrastok hala adierazten dutelako. XVI. mendean tipikoak izan ziren silarri luzenkak dauzka osteko eta aurreko fatxadan, eskuma aldean, leiho molduratua eta barruan izandako dolarearen elementu batzuk, sasoi hartan baserri askok zeuzkatenak, baina gutxik mantendu dituztenak. Beranduagokoa da gaur egun ikusten duguna, XVIII. mende ingurukoa, eta berriagoa oraindik kortarako atea.

toponimia

*Alfontso Irigoien ikerlari ezagunaren ustez izen honetan dugun hitza Bizkaiko hiriburarekin lotu behar da. Badirudi Zallan ere errepikatzen den izen honetan aditza dugula baina esangura, "trama", iluna da. Dena dela aitortu behar da* -tua *amaiera gehienak aditzak direla, artikuluarekin.*




# Bilbatuaganekoa (-a) etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Bilbétugánekue / Lorentzona



43° 10' 49" 2° 35' 41" Berriz Irudiitan / J.A. Ramos

*"... la casería principal titulada Bilbatuaganecoa... radicante en jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, y su casa accesoria... que comprende con inclusión de la caseta horno, zaguan y una pequeña huerta trescientos veinte y tres estados, equivalentes a doce areas y veinte y nueve centiareas de cabida; y las que se componen de una vivienda, con piso bajo y principal, con sus correspondientes divisiones, cuadras y habitaciones..."*
*DJE 3/22 or. (1871)*

Arestian aipatutako *Bilbatua* baserrien artean kokatzen da *Bilbatuaganekoa*. XVIII. mendeko Bizkaiko su-erroldetan aurkitzen ditugu baserri honen gaineko lehen aipuak: *Bilbatua de Suso, Vilbatua de Suso* eta *Bilbatua de Suso* (1704, 1745 eta 1796). *Bilbatua* (**Ikus Bilbatua**) baserriaren ondoan kokatuta dago, eta ez dakigu zer punturaino lotura duen baserri horrekin. Dena den, garai berekoak omen dira. XIX. mende hasieran dokumentatzen da lehen aldiz *Bilbatuaganecoa* (1817, BAHP, A268/13) aldaera, eta hortik aurrera, forma bera mantenduko du, lehen komentatutako salbuespenarekin, 1859ko izendegian *Bilbátuas* moduan agertzen baita beste baserri biekin batera. XX. mendean *Bilbatu Ganecua* (1905, BUA, 40) eta *Bilbatuaganecoa* (1967, BUA, CE) dira formarik erabilienak. Auzotarren artean, *Bilbétugánekue* eta *Lorentzona* dira formarik erabilienak.

Berriz inguruan horren zabalduta dagoen tipologian eraikitako baserria da, nahiz eta desberdintasun batzuk dituen. Honetan ondoko *Bilbatua* (**Ikus Bilbatua**) baserriaren antza du, biek baitute kortako atea fatxada nagusian. Hiru gorputzez osatuta dago, erdian atartea izanik. Harlangaitza erabili bazuten ere horma nagusiak egiteko eta harlandua kantaletan, egurrezko egitura oso bistakoa du lehenengo solairuan eta barne aldean, baita atartearen eskuma aldeko zutoinean ere, kontrastea eginaz beste aldeko harlanduekaz. Leihoetan antzeko desberdintasunak suma daitezke. Bakarra kontserbatzen du ertz guztiak harlanduzkoak dituena, korta gainekoa hain zuzen, eta kontrako aldean, oinarria duena beheko solairuan. Isuri biko teilatua du.

toponimia

*Alfontso Irigoien ikerlari ezagunaren ustez izen honetan dugun hitza Bizkaiko hiriburarekin lotu behar da. Badirudi Zallan ere errepikatzen den izen honetan aditza dugula baina esangura, "trama", iluna da. Bizkaian, behin baino gehiagotan esan dugun legez, ohikoa da etxe izenetan auzoa izena, jatorriz etxe baten izena zena, beste ezaugarri bereizgarri batez lagunduta agertzea. Kasu honetan Bilbatu auzuneko etxe hau goikoa da.*



# Bilbatuazpikoa

etxebizitza

Aldaerak: Kondeena
Ahozkoa: Bilbétu / Kondíena

*"... la casería rústica titulada Bilbatua-azpicoa... situada en la Cofradía o barriada de Andicona de la Anteiglesia de Berriz, que comprende su horno y un retazo de horno [huerto] trescientos quince estados, equivalentes a once areas noventa y ocho centiareas de cabida, y la que se compone de sus correspondientes pisos, cuadras, divisiones y habitaciones... "*
*DJE 3/74 or. (1872)*



*43° 10' 48"* *2° 35' 40"* *Berriz IrudITAN / J.A. Ramos*

Andikoa kofradiaren hegoaldean aurkitzen dira *Bilbatua* etxeak, *Etxosteko motearen* babespean. Bizkaiko su-erroldetan agertzen dira lehenbizikoz *Bilbatuazpikoa* baserriaren gaineko aipamenak: *Bilbatua de Yuso* (1704) eta *Uilbatua Aspicoa* (1796). Izenaren bigarren osagaiak argi erakusten digu bertan *goikoa* edo *ganekoa* izen-osagaia duen beste baserriren bat dagoela, *Bilbatuaganekoa* (**Ikus Bilbatuaganekoa**), hain zuzen ere. XVIII. mendeaz geroztik, dokumentazioan *azpikoa* eta *beazkoa* aldaerak tartekatzen dira: *Bilbatua Beazcoa* (1762, BAHP, A465/32), *Bilbatua Azpicoa* (1825, PE/1825) eta *Bilbatu Azpicua* (1905, BUA, 40). 1859ko Nomenclatorrean *Bilbátuas* agertzen da, lehen aipatu bezala etxe guztiak *Bilbatuas* izenaren pean multzokatzen baititu, inongo bereizketarik egin gabe. Auzotarren artean ere, maiz *Bilbétu* izenarekin identifikatzen dituzte etxe horiek, eta kasu honetan aztertzen dugun hau, zehazki, *Kondíena* moduan ezagutzen da.

Aldi desberdinetan burututako baserria da, parterik zaharrena XVI. mendekoa delarik. Dolare-baserria deritzen horietakoa zen jatorrian. Oraindik ere, dolarearen aztarnak gordetzen dituelako barruan, baita upategia ere sotoan, erripa aprobetxatuz egin zena. Horrez gain, garai horretakoak ditu bi leiho berezi: barnealdean bata, arkuduna, eta kanpoan bestea, molduratua. Edozelan ere, gaur egun ikusten duguna mende batzuk beranduagokoa da, sarrerako dinteldun ate txikiak ondo adierazi moduan. Fatxada oso sinplea da, denboran zehar hainbat aldaketa izan dituen arren, balkoia kasu. Erdian, sarrerako atea dauka, horren gainean balkoia harrizko mentsuletan eutsita, eta, azkenik, ganbaran, alderik alde doan egurrezko balkoia dauka. Erabilitako materiala harlangaitza da, eta harlandua, aldiz, kantaletan eta baoetan. Teilatua isurki bikoa da.

toponimia

*Alfontso Irigoien ikerlari ezagunaren ustez izen honetan dugun hitza Bizkaiko hiriburarekin lotu behar da. Badirudi Zallan ere errepikatzen den izen honetan aditza dugula baina esangura, "trama", iluna da. Bizkaian, behin baino gehiagotan esan dugun legez, ohikoa da etxe izenetan auzoa izena, jatorriz etxe baten izena zena, beste ezaugarri bereizgarri batez lagunduta agertzea. Kasu honetan Bilbatu auzuneko etxe hau behekoa da.*

# Erreiñusolo

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa:



*43° 11' 9"* *2° 35' 45"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

XX. mende amaieran eraikitako txaleta da, *Sarriugarte* (**Ikus Sarriugarte**) baserriaren lurretan jasoa. Eraikin berria izendatzeko, soroaren izena hartu dute, *Erreiñusolo* alegia.

Isuri biko teilatua badauka ere, fatxada modu asimetrikoan du antolatua. Solairu bakarra eta ganbaradun etxea da. Azken hau argitzen da bi leihoren bitartez, gailurraren arabera jarriak. Beheko baoak, berriz, guztiz alde batera dauzka. Atea bat dator etxearen ardatzarekin, baina eskuma aldea indartsuagoa da leihoei dagokienez. Horri laguntzen dio, gainera, fatxadari paralelo egin dioten aterpeak, ez baitu etxea alderik alde babesten. Hormak luzituta ditu eta harria erabili dute zokaloa egiteko, kantalak indartzeko eta ganbarako leihoen ertzak dotoretzeko.

toponimia

*Leku izen honen osagaiak argiak badira ere,* erreinu *eta* solo*, azalpena iluna da guretzat.*



# Erroteta

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Erróteta

*"... una casería titulada Erroteta... en el barrio de Sarria de la anteiglesia de Berriz... se compone en la planta baja de cocina zaguan, cuadras y un aditamento horno de pan cocer por el lado Norte, en el piso principal de cuatro cuartos, un departamento que fue cocina y el resto pajar, y encima camarote, mide un planta de trescientos veinte y seis metros y sesenta y tres decímetros. La Ferreira vieja, unida a la casa por el lado oeste de esta, que en la actualidad solo sirve de tejabana ó deposito de leña... dos tejabanas unidas situadas contiguas y hacia sur de la Ferreira vieja y casa... están destinadas a cuadras sin distribuciones interiores..."*
*DJE, 6/88 or. (1892)*



*43° 10' 57"* *2° 35' 58"* *Berriz Irudian / T. Angoitia*

*Arrierreka* ibaiaren urak aprobetxatzen zituen errota honen gaineko lehen aipu dokumentala Bizkaiko su-erroldan aurkitzen dugu: *Roteta* (1704). Badakigu errota XVII. mendean jada martxan zegoela, horrela ikusten baita Valladolideko Kantzelaritzan topaturiko irudi batean. Izenak aldaketa txikiak jasan ditu dokumentazioan, eta *Roteta* (1857, BUA, Viv.), *Rotaeta* (1865, DJE, 1/ 185. or.), eta *Erroteta* (1910, BUA, RU.) izan dira aldaera bakarrak. Auzotarren artean ere, ahozko transmisioan *Erróteta* era erabilia izan da.

Askotan gertatzen den moduan, kasu honetan ere burdinola zegoen errotari atxikia. Olarentzat beharrezkoa zen ur-aldaparoa gorde badu ere, gaur egun errota izandakoaren hormak baino ez daude zutik tamalez. Horrelako eraikinetan ohikoa den legez, bi isurkitako teilatua zuen. Harlangaitzezko hormak ditu, eta, tarteka, harlandua erabili zuten etxearen kantaletan, atartean eta leiho-ertz batzuetan, baita egurra ere beste hainbatetan.

toponimia

*Izen gardena, itxuraz, baina azalpen xumea behar duena. Izenaren osagaiak argiak omen dira,* errota *hitz arrunta eta hainbat lekutan aurkitzen dugun* -eta *atzizkia. Baina zer esan nahi du-eta atzizki honek? Urtetan uste izan zen plurala zela* eta *deklinabidea zela jatorria. Euskaraz "errotak" esaten badugu, deklinatzean -eta tartekatzen dugu:* Errotetara, Errotetatik, Errotetan... *Baina errealitatea bestelakoa da eta hau askotan egia bada ere argi dago errota bakarra zegoen leku honetan azalpen horrek ez zuela inolako zentzurik, beste hainbat lekutan bezala eta atzizki hau lekua zela adierazteko erabiltzen zela. Gaztelaniaz ez dago horrelakorik baina itzuli beharko bagenu "el lugar del molino" moduko zerbait esan beharko genuke.*





# Etxaurren

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa:



*43° 11' 24"* *2° 35' 13"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

XXI. mende hasieran egindako txaleta dugu honako hau, *Andikoagoitia* (**Ikus Andikoagoitia**) baserriaren etxe aurreko soroan.

Txalet berria da, euskal baserrien tankera berriztatuan egindakoa. Solairu bakarraz eta teilatupeaz osatuta dago, isurki biko teilatua aprobetxatuz egina. Apenas igartzen den fatxada asimetrikoa du, eta erdialdea gailentzen da. Izan ere, bertan du atartea, barrurantz sartuta, eta gainean, balkoia. Atartearen alde batean leiho bi ditu, eta bestean, aldiz, bakarra. Hormak luzituta ditu, balkoian ezik, bertan adreilua erabili baitzuten. Tradizioari jarraitzeko asmoa igarri daiteke, harlanduzko kantalak jarri zituztelako eta egurra usatu zutelako leihoen dinteletan, pisuen arteko imitazioko zurburuetan eta teilatuko zurajean.

toponimia

*Bizkaian ohikoa izan da etxe berria eraikitzean edo auzoaren izena eta etxea dagoen lurraren izena hartzea eta bigaren aukera hau da kasu honetan erabili dena. Kasu honetan etxearen aurrean zegoen lurrean eraiki zen eta bertako izena hartu zuen.*



**_Nuévo Nomenclátor_**

**_Provincia de Vizcaya_** **_Partido judicial de Durango_**

**_Ayuntamiento de Verriz_**

| Nombres de las poblaciones y viviendas | Clase de las mismas | Distancia a la cabeza del Ayuntamiento |
|---|---|---|
| *Aguírre* | *Casa de labor* | *1,800 metros* |
| *Aguírre-góitia* | *Casa de labor* | *2,880 metros* |
| *Andícona* | *Caserío con Hermita* | *3 kilometros* |
| *Andicóna-goéna* | *Casa de labor* | *3,400 metros* |
| *Andícona-góitia* | *Casa de labor* | *3,390 metros* |
| *Andícona-mayor* | *Casa de labor* | *3,200 metros* |
| *Asóla* | *Casa de labor* | *1,300 metros* |
| *Basaguchías* | *Casa de labor* | *2 kilometros* |
| *Bilbátuas* | *Casa de labor* | *2,700 metros* |
| *Erroteta* | *Casa de labor* | *2,777 metros* |
| *Ybárra* | *Casa de labor* | *2,500 metros* |
| *Larrinbúru* | *Casa de labor* | *1,310 metros* |
| *Lebariétas* | *Casas de labor* | *2,780 metros* |
| *Lupióla* | *Casa de labor* | *2 kilometros* |
| *Ortugúren* | *Casas de labor* | *3,250 metros* |
| *Salditúrrias* | *Casa de labor* | *1,320 metros* |
| *Zugatza* | *Casa de labor* | *2 kilometros* |

*BUA / Udal izendegia, 1859.*




# Gangutia (-a)

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Gángutti



*"... la Anteiglesia de Berriz, que comprende setenta y seis estados, equivalentes a doscientos ochenta y nueve metros de cabida, y la que es de dos habitaciones con sus correspondientes pisos cuadras y divisiones..."*
*DJE 3/98 or. (1872)*

*43° 11' 9"* *2° 35' 26"* *Berriz Irudita̲n / T. Angoitia*

Baserri honen gaineko lehen arrasto dokumentala Bizkaiko su-erroldetan aurkitzen dugu 1745ean, *Gangutia*, alegia, eta horrela mantendu da mendeetan zehar, aldaera gutxirekin: *Gangutia* (1825, PE/1825), *Ganguticua* (1865, DJE, 1/133. or.) eta *Gangutiena* (1905, BUA, 40). Maiz nahastu ohi da baserri hau auzoaren behealdean Sarria alderantz doan bidearen ondoan aurkitzen diren *Gangoitienabekoa* (**Ikus Gangoitienabekoa**) eta *Gangoitienagoikoa* (**Ikus Gangoitienagoikoa**) baserriekin. Auzotarren artean *Gángutti* da forma erabiliena.

Bizitza biko baserria, bere fatxadan oso ondo ikus daitekeen moduan, guztiz era simetriko eta garbian antolatuta baitago. Hala ere, etxearen erdialdea dauka indartuta, banaketa sentsazioa ahulduz. Baoetan leihoak badira nagusi ere, sarrera eta balkoiak han zabaldu zituzten. Hala, atartera bi arkuren bitartez sartzen da, harlanduzko alfiz moduko batek bereizita. Arku bakoitzaren gainean balkoi bana dauka eta gorengo pisuan, balkoi luzea, erdialdeko lau baoak lotzen dituena, etxean nagusitzen den goranzko joera apurtuz. Teilatuaren formari ego-

toponimia

*Basagutxia (**Ikus Basagutxia**) sarreran esan dugun bezala gutxi eta aldaera den guti hitzek "txiki" esan nahi zuten. Araban Artzeniega ondoan Soxo eta Soxoguti herriak ditugu adjektibo honen mendebaldeko erabileraren lekuko. Beraz Gaintxikia esango genuke gaur egun.*





*Gerediaga Elkartea / T. Angoitia*

kituta, ganbaran leihotxo bi daude eta bigarren solairuan, bana, izkinetan. Oraintsu eraberritze sakona jaso du eta lehen estalita zegoen harlangaitza bistara atera dute, *Urretxandikoan (***Ikus Urretxandikoa***)* egin duten legez, *Zelaietarekin* (**Ikus Zelaieta**) duten antz ukaezina ahulduz. Hala ere, harlanduak nabariak dira kantal eta bao guztien ertzetan, kolore gorrixkak ere horretara laguntzen baitu. Isuri biko teilatua dauka. Atartean, barruan, etxeen sarrerako ateak daude, biak dinteldunak eta bakoitzak inskripzio bat du biribil batean eta gurutzearen alde banatan. Ezkerrekoak honela dio: *"IESUS / 1581"*. Eskumakoak, ostera, *"IESUS/ 1912"*. Fatxadan ere beste inskripzio bat dago, gaur egungo etxea noizkoa den argitzen duena: *"REEDIFICADO / POR / DOMINGO MARIA GANGUTIA / PETRA IRASOLA / CONSORTES / 1912"*.

# Gangoitienabekoa

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Gángotin bekúe



43° 10' 58" 2° 35' 56" *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Andikoatik Sarriarantz doan bide ondoan eta *Arrierreka* ondoan kokatzen den baserri honen inguruko aipuak, *Gangoitienagoikoa* baserriarekin (**Ikus Gangoitienagoikoa**) gertatzen den moduan, eskasak eta nahasgarriak dira. XX. mende hasieran aurkitutako informazioan *Gangutiena* (1905, BUA, 40) moduan agertzen da baserri hau, *Gangoticoa* (*Gangoitienagoikoari* erreferentzia eginez) eta *Gangutia* baserrietatik bereiztuz. Dena den 1967ko eraikin zentsoa izango da argiena, bertan *Gangutiena becoa* (BUA, CE) aurkitzen dugu metro batzuetara duen *Gangutiena goicoa* baserritik bereiztuta. Auzotarren artean *Gángotin bekúe* da forma erabiliena.

Baserri etxe ederra, atarteko arkuak ondo definitzen duena. Pisu bikoa da, goikoa teilatuaren formari egokitzen dena. Leiho gutxi dituen arren, arkua da fatxada nagusiari bizitasuna ematen diona. Gainean, leiho luzea du, etxearen ardatza indartuz. Eta honen alde banatan, leiho bana pisu bakoitzean, txikienak goikoak izanik. Isuri biko teilatuak oso hegal zabalak dauzka eta horretarako, beste hainbat baserritan legez, egurrezko besoak erantsi behar izan zizkioten. Erabili zuten materiala harlangaitza izan zen hormetarako eta harlandu gorrixka, ostera, kantalak eta bao ertzetarako. XIX. mende hasiera inguruan jasotako etxea izan daiteke.

toponimia

*Izen hau eta* Ganguti *oso antzekoak badira ere esangura desberdina da kasu honetan* bekoa *baita bigarren osagaia. Gaur egun* bekoa *erabiltzen baditugu ere, antzina* beiti *erabiltzen genituen etxe izen eta deituretan ikus daitekeen bezala.*



# Gangoitienagoikoa etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Gángotin goikúe



*43° 10' 56"* *2° 35' 51"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Andikoa eta Sarria kofradiak banatzen duen *Arrierrekatik* gertu koka-tzen den baserri honen inguruko aipuak eskasak dira, edo hobe esanda kofradiaren goiko auzoan aurkitzen den *Gangutia* (**Ikus Gangutia**) baserrien aipuekin nahastuak ageri dira. Horrela 1704. urteko Bizkaiko su-erroldetan *Gangoytia* moduan agertzen zaigun aipua baserri honekin lotu behar dugu. Hortik aurrera momentu desberdinetan antzerako erak agertzen dira, esate baterako 1840. urtean *Gangoitia* (BAHP, A172/19) edo 1863. urteko *Gangotide* (DJE, 1/ 39 or.). Dena den XX. mendearen bigarren erdialdekoak izango dira argienak. Horrela 1967ko eraikin zentsoan *Gangutiena goicoa* (BUA, CE) aurkitzen dugu metro batzuetara duen *Gangutiena becoa* baserritik bereiztuta. Auzotarren artean *Gángotin goikúe* da forma erabiliena.

Askotan ikusi dugun hiru gorpuzdun baserria da, XVI. mendeko alde zaharragoaz baliatuta beranduago egindakoa, eskuma aldekoaz hain zuzen ere. Aldamenekoak harrizkoak dira, harlangaitzezko hormekin jasoak, eta erdian atarte zabala dauka. Hain da zabala ezen, ordena toskanarreko koloma duela euskarri moduan, 1727ko datarekin. Kantaletan eta solairu honetako leihoetan harlandua erabili zuten. Goiko pisuak, berriz, egurrezko egituraz armatu ziren, tarteko hormak adreiluzkoak izanik eta leihoak, zurezkoak. Ganbara aldea zabalik dago, balkoi bihurtua. Isuri biko teilatua du. Gaur egun guztiz eraberrituta ageri da eta material desberdinen kolore jokoa erabili dute etxeari bizitasuna emateko.

toponimia

*Izen hau eta* Ganguti *oso antzekoak badira ere esangura desberdina da kasu honetan* goikoa *baita bigarren osagaia. Gaur egun* goiko *edo* ganeko *erabiltzen baditugu ere antzina* goiti *eta* beiti *erabiltzen genituen etxe izen eta deituretan ikus daitekeen bezala Bizkaian, behin baino gehiagotan esan dugun legez, ohikoa da etxe izenetan auzoa izena, jatorriz etxe baten izena zena, beste ezaugarri bereizgarri batez lagunduta agertzea. Kasu honetan Gangoiti etxeen arteko goikoa da.*





# Gasparrena (-a) etxebizitza

Aldaerak: Zaldituriagirre
Ahozkoa: Kásparrena / Kaxpárrena



43° 10' 43" 2° 35' 13" Berriz Iruditan / J.A. Ramos

*"... la casería rústica titulada Saldi-Yturri-Aguirre o Gasparrena... sita en la cofradía de Andicona de la Anteiglesia de Berriz, es de una vivienda compuesta de piso bajo con su cocina, cuarto y cuadras, y otro alto con su camarote y pajares,... ocupa con inclusión de la tejavana, horno y zaguan setenta y cinco y medio estados..."*
*DJE 5/2 or. (1881)*

XVIII. mendean aurkitzen ditugu baserri honen gaineko lehen aipamenak Bizkaiko suerroldetan: *Gasparrena* (1704 eta 1745). Aldaketa gutxi jasan duen izena da honako hau, nahiz eta behin baino gehiagotan dokumentazioan *Zalditurri Aguirre* (1802, BAHP, A425/8) moduan ere agertu. Horrela jasotzen da, adibidez, jabego-eskrituran: *Saldi-Yturri-Aguirre* eta *Gasparrena* (1881, DJE, 5/ 2. or.). Dena den, XX. mendean *Zalditurri Agirre* desagertu, eta *Gasparrena* moduan bakarrik dokumentatzen da, 1967ko Udal-erroldan kasu. Berriztarren artean, *Kásparrena* eta *Kaxpárrena* dira formarik erabilienak ahozko transmisioan.

Ez da etxe handia harrizko eraikin zahar hau, ez behintzat beste baserri batzuekin konparatzen badugu. Isurki biko teilatuaren azpian, pisu bi eta teilatupea ditu. Harlanduz egindako bi leiho ditu solairu bakoitzean, ganbaran izan ezik, bertan fatxadaren bertikaltasuna hausten duen hormigoizko balkoi zabala dagoelako. 2008. urtean egindako azken berriztatze-lanetan aldaketa sakona egin zioten, bizitza bikoa bihurtzeko. Etxe zaharrenari harlangaitza desestali egin diote, atzean erantsita daukan eraikinaren antzera, eta horrek alde berriagoaren horma luzituekiko kontrastea handitzen du.

toponimia

*Bestelako azalpenik behar ez duen etxe izan* Gaspar *pertsona izenaz eta etxea adiera duen* -ena *atzizkia. Nahiz eta Bizkaiko deituretan* -ena *amaiera gutxi ageri, oso ugariak dira horrelako egitura duten baserriak baina berriagoak dira deitura eman dutenak baino.*



# Ibarra (-a)

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Ibérre

*"... una casería titulada Ybarra, radicante en termino de la anteiglesia de Berriz, Cofradía de Andicona, es de dos viviendas, compuesta de sus cocinas, la una con un cuarto en piso bajo con sus cuadras y portalada, y la otra de piso alto con sus cuartos, camarotes y pajares... contienen su planta solar con inclusión de la teja-bana, horno y zaguan noventa estados o tres áreas y cuarenta y dos centiareas..."*
*DJE 5/136 or. (1884)*



*43° 10' 40"* *2° 35' 38"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Andikoa eta Eitua kofradien artean kokatzen den *Ibarra* baserriaren gaineko lehen aipuak XVIII. mende amaieran aurkitzen ditugu: *Ybarra* (1787, BAHP, A311/33) eta *Ybarra* (1796, Bizkaiko su-errolda). Aldaketa gutxi jasaten dituen izen horietakoa dugu, dokumentazioan forma bera mantentzen baita XX. mendera arte, inoiz y grekoaz idatzi beharrean i latinoaz idatzita agertzen den arren: *Ybárra* (1859, BUA, Nmcr) eta *Ibarra* (1967, BUA, CE). Auzotarren artean, *Ibérre* da erabilitako forma.

Bizitza biko baserria da. XVII. mendean hedatu zen trazan jasotakoen antza badu ere, ez da bete-betean haien ereduan sartzen. Hiru gorputzez osatuta dago, baina ezkerrekoak etxearen erdia hartzen duen bitartean, beste erdia eskuma aldeko gorputza eta atartearentzat da, egurrezko dintelaren babesean dagoena. Erabilitako materiala harlangaitza da, harlandua kantal eta leiho ertz baterako izanik. Hau beheko solairuko eskuma aldekoa da eta buruan gurutzea du. Ganbara aldean, ostera, egurrezko egitura bistan da, gutxi bada ere, horma meheagoak bezala. Barruak argitzeko leihoak dauzka eta atarte gainean, balkoi bakarra, zurezkoa. Isurialde biko teilatua du eta XVIII. mende amaieran eraikitako baserria izan daiteke.

toponimia

*Euskal Herri osoan oso arrunta den etxe izen eta deitura dugu Ibarra. Hitzak bi adiera desberdin izan ditu euskaraz, haran hau da "valle" eta batzuetan izaera juridikoa ere izan du (Orbaibar erdaraz Valdorba) eta erreka edo ibai ondoko lur laua, erdaraz "vega". Azken adiera horretan ohikoa izan da Bizkaia eta Araban erdaraz ere. Azken adiera honen adibidea Bilboko auzo izen bat dugu, Abandoibarra, antzinako Abando udalaren ibarra zena.*



# Intxaurtze

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa:



*43° 11' 23"* *2° 35' 14"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*Ortuguren* (**Ikus Ortuguren**) baserriaren "*Etxeoste*" lurretan egindako txaleta da honako hau. Bertan intxaurrondoak zeudenez, horren izen parekoa edo sinonimoa den Iparraldeko euskalkien *Intxaurtze* hitza hautatu dute etxe berria izendatzeko.

2010ean eraikitako txaleta da. Pisu bakarra eta teilatupekoa dauka eta oso modu asimetrikoan du antolatua fatxada nagusia. Izan ere, alde batean kokatu dira garajea eta sarrerako aterpea, eranskin gisa, eta bestean, etxebizitza bera da nagusi. Eraikitzeko erabilitako materiala harria da. Salbuespena, luzitutako tarte batzuk eta egurrezko detaileren batzuk, esaterako, imitazioko kantaletako zutoinak, pisuen arteko egitura, teilatuaren hegalaren besoak, garajearen frontoia eta leihoburuak. Isurialde biko teilatudun etxea da.

toponimia

*Etxe hau eraiki zutenean ez omen zuten bertako toponimoa,* Intxaurrondo*, egoki ikusi, arruntegia zelakoan edo adarjotze bidea izan litekelako Donostiako auzo ezagunagatik. Baina izen berria asmatu beharrean zubererazko kidea den* Intxaurtze *jarri zioten etxeari.*



# Keixeta

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa:



*43° 11' 0"* *2° 35' 27"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

XX. mende amaieran egindako txaleta, *Aiaga* (**Ikus Aiaga**) parajearen goialdean.

Solairu bakarreko txaleta dugu, egin berria. Etxea asimetrikoa da, atea ardatzean kokatua dauka eta baoak leiho-itxurakoak ditu, zabalera desberdinetakoak. Isurki biko teilatuak babesten du, eta horrek sortzen duen ate gaineko espazioa leiho termal baten bidez argitzen da. Gainera, fatxada nagusiaren horizontaltasun nabarmena apurtzen du.

toponimia

Kerexa *eta ugaritasun edo besterik gabe lekua adierazten duen* -eta *atzizkiaz osatutako izena. Mendebaldean, bizkaieraz alegia,* lexar, elexa *eta* kerexa *dira batuan* lizar, eliza *eta* gerezi *arautako hitzak. Idazkera egokia* Kerexeta *bada ere, jabeeek ahozko aldaera nahiago izan zuten.*





# Larrinburu

etxebizitza

Aldaerak: Casa Cebrián.
Ahozkoa:



43° 11' 4" 2° 35' 23" Berriz Iruditan / J.A. Ramos

Egun desagertuta dagoen *Larrinburu* baserriaren gaineko aipuak nabariak dira XVIII. mendetik, hala jasotzen da Bizkaiko su-erroldetan eta beste zenbait dokumentutan: *Larrimburu* (1704), *Larrimbúru* (1859, BUA, Nmcr) eta *Larrimburu* (1905, BUA, 40). *Asola* (**Ikus Asola**) eta *Zalditurri* (**Ikus Zalditurri**) baserrien inguruan kokaturiko baserria zen; baina 1957. urtean sute baten ondorioz guztiz txikituta gelditu, eta desagertu egin zen. Gaur egun, arrastorik ez da gelditzen, eta pinudi bat aurkitzen dugu bertan.

2008. urtean abian jarritako toponimia ikerketaren irizpideak jarraituz, non desagertutako baserrien izenak berreskuratzeko esfortzua egin behar dela jasotzen den, XX. mende amaieran eraikitako txaletak, *Gangutia* (**Ikus Gangutia**) baserriaren terrenoetan eginda, desagertutako baserri horren izena hartu du, hemendik aurrera *Larrinburu* izenarekin ezagutuz. Orain arte eraikin hori jabearen abizenarekin ezagutu izan da, *Casa Cebrián*.

1957an erretako baserri haren izena badarama ere, XX. mendeko amaierako txaleta da. Etxea bolumen paralelo bik osatzen dute, estu eta luzexkak, paraje maldatsuari ondo egokituta. Eta, batak besteak baino pisu bat gehiago izanik, altueran berdindu egiten dira bolumen bien teilatuak. Bolumenen goranzko tendentzia teilatuaren azpiko ganbarako solairuak nabarmen hausten du, hedaduraz azpikoa baino handiagoa da eta. Etxearen azpialdera, berriz, atxikitako beste gorputz bat dago, teilatu eta guzti, bi solairu hartzen dituena eta begiratoki funtzioa betetzen duena. Baoei dagokienez, bi bolumenen alde estuenetan leihoak daude, bi ardatzetan antolatuta. Eta sarrerak bi dira, teilape batek gordeta. Bata goiko partean dago, alde luzeenari paralelo, eta bestea, beherengo aldean, fatxada estuenari erantsita. Hormak luzituta dauzka.

toponimia

*Etxe izen honen osagaiak* larrain *"garia jotzeko lekua", mendebaldean* larrin *moduan ezagutua, eta* buru *hitz arrunta dira: "Larrainaren gaintxoa".*



# Lebarietabarria etxebizitza

Aldaerak: Lebarietabarria
Ahozkoa: Lébaitte-barri



*43° 11' 2"* *2° 35' 50"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

XX. mende amaieran egindako txaleta, *Lebarietazpikoa* (**Ikus Lebarietazpikoa**) eta *Lebarietaganekoa* (**Ikus Lebarietaganekoa** baserrien artean. *Lebarieta* baserrien inguruan eraiki zenez, tradizioari jarraiki *Lebarietabarria* izena jartzea hautatu zuten.

Azken aldian Euskal Herrian eratu den euskal estilo berriztatuan egin zuten, hau da, isuri biko teilatuduna, horma luzitu eta zuriak, jokoa eginez pertsianen egurrarekin eta frontoiko adreilu eta egurrezko zurajearekin. Simetrikoa ez den arren bere fatxada nagusia, orekatua da oso, indarra jarri dutelako lehenengo pisuko hiru bao ederretan, teilatuaren gailurraren arabera kokatuak, eta zabaltzen direnak balkoi zabal bakarrera. Beheko plantako antolamendua ere, balkoi zabala kontuan hartzen badugu, antzekoa da. Horrela, sarrerako atarte dintelduna teilatuaren gailurra ardatz hartuta zabaldu zen, eta bere albo banatan, leiho bat, ezkerraldean, eta bi, eskumakoan.

toponimia

*Bizkaian izen askotan aurkitzen dugu* -io *amaiera eta denboran zehar azalpen desberdinak eman zaizkio hitzari. Gaur egun ikerlari gehienen ustez* -iano *amaiera baten lekukoen aurrean uste da eta hau dateke* Derio, Elorrio, Gomendio *edo* Lebario *izenen kasu bera. Kontua da antzina euskaraz bazirela* n *mota bi, latinez bezala, gogorra, inoiz* nn *idatzi zena eta leuna, baina orain dela mila urte baino gehiago leuna desagertu egin zen. Horren ondorioz latineko catena eta arena euskaraz* katea *eta* (h)area *bihurtu ziren era* ardano *eta* gaztana *hitzak* ardoa *eta* gazta*. Leku izenetan ere gertatu zen eta* Ochandiano *eta* Ceberiano *herri izenak* Otxandio *eta* Zeberio *bihurtu ziren.* Ano *amaiera horrek jabetza adierazten zuen, gure egungo* -ena *bezala eta aurrean pertsona izenak ageri dira nahiz eta gehienetan izen horiek ezezagunak izan. Lebarioren kasuan* Lebarius *izena egon liteke atzean. Kasu honetan Lebario izenari eta atzizkia gehitu eta* Lebarieta *eman zuen. Izenaren bigarren osagaiak* -barria, Lebarieta *etxe inguruko berriena dela adierazten du.*

# Lebarietaganekoa etxebizitza

Aldaerak: Lebarietagoikoa
Ahozkoa: Lébaittegoikúe / Lébaitte



43° 11'2" 2° 35'44" *Berriz Irudítan / T. Angoitia*

*"...una casería denominada Lebarieta ganecua sita en el barrio de Andicona... radicante en jurisdicción de Berriz... se compone de una vivienda, piso llano, principal y camarote, mide un área y sesenta y ocho centiareas equivalentes a cuarenta y cuatro estados y veinticinco centimos..."*
*DJE 7/1 or. (1897)*

*Erroteta* (**Ikus Erroteta**) errotatik gertu kokatzen dira *Lebarieta* etxeak (**Ikus Lebarietazpikoa eta Lebarietabarria**), eta tartean, honako hau, *Lebarietaganekoa*, alegia. XVIII. mendeko Bizkaiko su-erroldetan aurkitzen ditugu baserri honen lehen aipuak: *Lebarueta* (1704) eta *Levarioeta* de *Suso* (1745), behealdean kokatzen zen beste baserritik bereizteko. 1825eko polizia-erroldan ageri da lehendabiziz *Levarieta ganecoa* (PE/1825) era, eta hortik aurrera nagusituko den forma izango da; *Levaitaganecoa* (1863, DJE, 1/ 27. or.), *Levarieta Ganecua* (1905, BUA, 40) eta azken Udal-erroldan aurkitzen dugun *Lebarietaganecoa* (1967, BUA, CE) dira horren adibide. Berriztarren artean *Lébaittegoikúe* eta *Lébaitte* dira ahozko formarik erabilienak.

XX. mende amaieran berriztatu ondoren, errotik aldatu zen baserria. Ehun urte lehenago egindako deskribapenaren arabera, etxe xumea zen; baina egungo beharretara moldatu dute, oso eraikin koloretsu eta bizia bilakatuz. Alderik zaharrena harrizko gorputza da, leihoak hegi molduratuz hornituta dituena, eta jatorrizko egurrezko egitura guztiz eraberritu dute, tarteko adobea adreilu egosiekin ordezkatuta. Berria da ere burdinazko zutoinen gainean egindako begiratokia, etxean guztiz integratuta ageri zaiguna. Parte zaharra XVIII. mende inguruan eraikitako baserriari dagokio.

toponimia

Lebarietabarria *izenaren inguruan azaldutakoari gehitu (***Ikus Lebarietabarria***) behar zaio, kasu honetan* Lebarieta *hitzari erantsitako* -ganeko *amaierak "goiko etxea" dela esaten digu.*



# Lebarietalde

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa:



*43° 11' 1"* *2° 35' 38"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

XX. mende amaieran eraikitako txalet hau *Lebarietaganekoa* (**Ikus Lebarietaganekoa**) baserrira doan bidearen goialdean kokatzen da. Kokapenari men eginez, *Lebarietalde* izena hartu du.

Euskal estilo berrian egindakoa. Egitura sinplekoa eta solairu bakarrekoa bada ere, teilatupea ere gehitu zitzaion, fatxada nagusiko balkoiaren bidez nabarmentzen dena. Aldameneko fatxada, berriz, negutegi itxurakoa da, eta beste aldean, zerbait atzeratuago, atea du kokatuta. Hormak luzituta dauzka, eta tradiziozko eraikuntzaren zantzuak ikusten zaizkio kantaletako harlanduetan eta goiko solairuzko egurimitaziozko egituran. Isurki biko teilatua du.

Oro har, txalet berria da, tradizioan oinarriak dituena. Isurki biko teilatuaren azpian etxe luzanga ikusten dugu, oinplanoan sartu-irtenak dituena, fatxada nagusia ez baita erabat zuzena. Joko horrek sarrera indartzen du, eta simetria-eza arindu. Fatxadan balkoiak nagusitzen dira, kanpoalderantz irtenak lehenengo pisuan, eta barrualdera sartuta, ganbaran. Hormak lutzituta eta zuriz pintatuta baditu ere, egurraren erabilerak eta egituraren sartu-irtenek alaitasuna ematen diote fatxadari. Zur-imitaziozko egiturak eta egurrezko leihoburuak eta pertsianak ere horretan lagungarri dira.

toponimia

Lebarietabarria *izenaren inguruan azaldutakoari gehitu (***Ikus Lebarietabarria***) behar zaio, kasu honetan, atzizkiari* -alde *postposizioa gehitu zitzaion, toponimo berria sortzeko.*

# Lebarietazpikoa etxebizitza

Aldaerak: Apraizena / Txirloena / Txirbiena
Ahozkoa: Lebáittaspí / Apráixena / Txírbiñe / Txirlóiena



43° 10' 59" 2° 35' 53" Berriz Iruditan / J.A. Ramos

*"... la casería rústica titulada Lebarieta azpicoa... situada en la Cofradía de Sarria jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende con inclusión de su zaguan setenta estados cuadrados superficiales de planta solar, y la que se compone de una vivienda de un piso y entresuelo..." DJE 1/137 or. (1865)*

*Lebarieta* etxeen artean azpikoa dugu honako hau, *Lebarietazpikoa* alegia. Bizkaiko su-erroldetan jasotzen da, XVIII. mende amaieran. *Lebarieta de Yuso* (1796) izenez agertzen da, *Levarioeta de Suso* etxetik bereizteko. Handik gutxira, *Lebarieta azpicoa* (1798, BAHP, A133/8) euskal forma jasotzen da lehenengoz, eta hortik aurrera, dokumentu guztietan aldaera hori mantenduko da; *Levarieta Azpicoa* (1825, PE/1825) eta *Levarieta-aspicoa* (1910, BUA, RU) ditugu horren adibide. Auzotarren artean, *Lebáittaspí* da formarik erabiliena, nahiz eta jabearen izenarekin lotzen diren ahozko izenak ere nabariak izan, besteak beste: *Apráixena*, *Txírbiñe* eta *Txirlóiena*.

Aldi desberdinetan eraikitako baserria da. Izan ere, XVI. mendeko silarriak nahasiak agertzen baitira beranduagoko harlangaitzezko hormetan integratua, edo ganbara aldeko egurrezko egitura, hau ere ondoren egindakoa, XIX. mendekotzat ere har daitekeena. Etxea erripan eraikita dago eta berari egokituta, oro har, luzenka izanik. Fatxada nagusian ere antzeman daitezke aldi desberdinetako zatiak, harriaren tailari erreparatu ezkero, atean zein leihoetan. Ganbarako hormak zurezko egituraz burutu ziren, tarteko adreiluzko hormekin, enfoskatu eta pintatuta. Teilatua bi isurkitakoa da.

toponimia

Lebarietabarria *izenaren inguruan azaldutakoari gehitu (***Ikus Lebarietabarria***) behar zaio, kasu honetan* Lebarieta *hitzari erantsitako -azpiko erantsi zaio, eta horrek beheko etxea dela argitzen digu.*



# Lupiola

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Lupióla

*"... la casería rústica titulada Lazpita-lupiola... situada en la barriada de Andicona jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende ciento cincuenta y siete y medio estados, equivalentes a quinientos noventa y nueve metros cuadrados de cabida con inclusión de su terreno antusano y horno, la que es de una vivienda y se compone de piso llano alto y desban, con sus correspondientes cuadras, divisiones y habitaciones..."*
*DJE 2/196 or. (1866)*



*43° 10' 59"* *2° 35' 12"* *Berriz Irudítan / J.A. Ramos*

Seguruenik XVII. mendean jatorria duen baserri honen gaineko aipuak Bizkaiko su-erroldetan aurkitzen ditugu lehendabiziz: *Lupiola* (1704). Kasu honetan, *Ibarra* (**Ikus Ibarra**) baserriaren izenarekin bezala, aldaketa gutxi eskaintzen duen izen baten aurrean gaude. Izan ere, mendez mendeko dokumentazioan forma bera aurkitzen dugu; *Lupiola* (1825, PE/1825), *Lupiola* (1910, BUA, RU) eta *Lupiola* (1967, BUA, CE) aipuak dira horren adibide. Ahozko erabileran ere, *Lupióla* da formarik erabiliena.

Nahiz eta XVII. mendean errotutako baserrien tipologia antzeman, orain ikusten dugun etxea berria da, zaharragoaren hainbat arrasto mantendu baditu ere. Horren adibide lirateke alboetako harrizko bi gorputzak eta zuresko dintela duen erdialdeko atartea, zutiko eta guzti. Horren gainean, hormigoizko balkoi batera zabaltzen dira bi leiho luze. Erdialdeko gorputza luzituta dago, eta fatxadako frontoian egurrezko egitura imitatu dute. Bi isurkitako teilatua dauka.

toponimia

*Badirudi etxe izen honetan* Lope *pertsona izena dugula eta hain arrunta den* ola*:* Loperen ola*. Esan dugun bezala* ola *hitzak bi adiera nagusi izan ditu historian zehar. Basoan, herri basoetan zehatzago, egiten zen hesi biribila, geroago "kortabaso" deitua, erdaraz "sel", eta geroago hartu zuen adiera, "burdina lantzeko etxea".*





# Mainpe

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa:



43° 11' 6" 2° 35' 30" Berriz Iruditan / J.A. Ramos

Andikoa bidean eginiko etxea da hau. *Marien* (**Ikus Marien**) baserriaren azpialdean kokatzen da, eta hortik datorkio izena. Ahozko forma abiapuntu hartuta, hau da, *Máin*, etxearen izena osatu da: *Mainpe*.

1981ean egindako txaleta da, oso modu sinplean antolatutakoa. Bi isurkitako teilatupean, bi pisutako etxea daukagu, atea albo batean dauka, eta leihoak neurri desberdinetakoak ditu. Fatxadak luzituta eta pintatuta daude.

toponimia

Marien *(***Ikus Marien***) baserri izenaren gainean esan dugunarekin lotu behar dugu honako izen hau.* Marien *baserriaren behekaldean kokaturik dagoen etxea da* Mainpekoa*. Izen honetan berriztarren artean erabilitako* Máin *forma gehi kokapenari dagokion* -pe *elkartzen dira,* Mainpe *izena osatuz.*



# Marien

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Máin



*43° 11' 9"* *2° 35' 29"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*Gangutia* (**Ikus Gangutia**) baserriaren beheko aldean kokaturiko baserri honen gaineko lehen aipamenak Bizkaiko su-erroldetan aurkitzen ditugu, XVIII. mendeko lehen urteetan: *Marien* (1704). Mende horretan zein XIX. mendean, forma hori mantenduko da batez ere; *Marien* (1808, BAHP, A174/10) eta *Marien* (1864, DJE, 1/ 98. or.) aipuak ditugu horren adibide. XX. mendean, aldiz, aldaera desberdinak ditugu: *Maringua* (1905) BUA, 40) eta *Marin* (1910, BUA, RU), eta 1967an, berriz ere, *Marien* (BUA, CE). Andikoatarren artean, *Máin* izan da baserria identifikatzeko era.

Baserri handia da, are gehiago eskuma aldean erantsita daukan gorputza gehitzen badiogu. Solairu bi eta ganbaradun etxea da, harlangaitzaz jasoa, nahiz eta kantalak eta leihoen ertzak harlanduzkoak diren. Fatxada nagusiaren elementurik bereziena atarteko sarrera arkua da, etxearen ardatzean. Baoei begiratzen badiegu, esango genuke arkuaren gaineko biak eta ezkerraldekoak ordena jakin baten arabera zabaldu zirela eta eskuma aldekoak, ostera, beste planteamendu bati erantzuten diotela. Ganbaran hormigoizko balkoia dauka, egurrezko kareldunа. Isuri biko teilatua dauka eta zeharo berrituta dago, XVIII. mende amaiera edo XIX. mende hasierakotzat hartu badaiteke ere.

toponimia

*Oso izen eder eta berezia da hau. Gure irudiko* "Mariren etxe" *esan nahi du eta berezia da holakoetan, ia gutzi-guztietan artikulua ageri delako (Abadena, Jakobena, Otxoena...) eta honetan berriz, badirudi Mari eta* -en *direla osagaiak. Bizkaian, horrelako oso gutxi dago eta dagoenean noren kasu normalarekin ageri da, Atxoaren, esaterako Bermeon. Izatez* -ena *atzizkia* noren *kasutik sortu zen, baina XVIII. menderako atzizki independientea zen "etxea" esangurarekin eta horregatik Mariren esan beharrean Marien zen.*

# Ortuguren etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Órtun



43° 11' 22" 2° 35' 15" Berriz Iruditan / T. Angoitia

*"... la casería rústica titulada Ortuguren... situada en la barriada de Andicona jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende con su horno, basurero y antusanos ochenta y cinco y octavo estados, equivalentes a trescientos veinte y cuatro metros cuadrados de cabida, y la que se compone de una vivienda con piso bajo y alto..."*
*DJE 2/138 or. (1866)*

Andikoako Goierrian kokatzen den baserri honen gaineko lehen aipuak XVIII. mendean topatzen ditugu: *Orttuguren* (1727, BAHP, A965/32). Polizia-erroldan ere forma bera aurkitzen dugu: *Ortuguren* (1825, PE/1825). Forma hori mantenduko da dokumentazioan gaur egun arte, salbuespen bi izan ezik, hots, *Hortuguren* (1867, JCR 2908/008) eta *Hortuguren* (1887, DJE, 5/ 231. or.), bertan h hizkiaz agertzen baita idatzirik. Auzotarren artean, *Órtun* moduan ezagutzen da.

XVII. mendean sendotu zen tipologian eraikitako baserria da. Hiru gorputzez osatua dago: alboetakoak harrizkoak dira, eta erdian atartea dauka, egurrezko dintelduna. Beste askotan legez, alde bat zaharragoa da, eta kasu honetan, ezkerreko parteari dagokio, estuagoa dena. Alde horretako fatxada nagusiko leihoa beste aldekoa baino txikiagoa da, eta hormetan, harlangaitzarekin batera, XVI. mendeko silarriak bereiz daitezke. Beheko solairuko leihoak harlanduzkoak badira ere, goikoetan egurrezko dintela erabili zuten. Aipatu berri ditugu harlandua eta harlangaitza material moduan, eta ohiko lekuetan ageri zaizkigu, hau da, kantaletan eta leiho batzuetan. Atarte gainean, ostera, tipikoa den egurrezko egitura dugu; adreilua, berriz, lehenengo solairuan, eta harria, azkenik, ganbaran. Isurki biko teilatua dauka, zeharo asimetrikoa dena, eskuman erantsitako gehigarriaren ondorioz. 2008. urtean guztiz eraberritu zuten.

### toponimia

*Leku izen honen osagaiak diren* ortu *eta* guren *oso interesgarriak dira hizkuntzaren historiaren aldetik. Latineko* hortus *hitzetik* ortu *hitza sortu zuen euskarak, eta* huerto *gaztelaniak, baina Mendebaldean baino ez da erabiltzen. Gainerako Euskal Herrian baratza baita erabiltzen den hitza.* Guren*, berriz, euskal hitz zaharra da eta "eder" esan nahi zuen. Hori bai, ortu batez ari garela edertasuna, seguruenik, beste modu baten ulertu behar dugu,* oparitasuna*.*



# Ortugurentxo etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Órtuntxo

*"... la casería rústica titulada Ortugurenchu... situada en la barriada de Andicona jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende con su zaguan horno y huertecita ochenta y ocho estados cuadrados superficiales de cabida, la que es de una habitación, y se compone de piso bajo y entresuelo, con sus correspondientes cuadras y divisiones..."*
*DJE 2/27 or. (1866)*



*43° 11' 22"* *2° 35' 17"* *Berriz Ruditan / J.A. Ramos*

*Ortuguren* (**Ikus Ortuguren**) baserriaren ondoan eraikitako baserriaren lehendabiziko aipamena 1825. urtean aurkitzen dugu: *Ortugurencho* (PE/1825). Ia aldaketarik gabe erregistratuko da dokumentazioan XIX. eta XX. mendeetan: *Ortugurenchu* (1866) DJE, 2/ 23. or.), *Ortugurencho* (1910) BUA, RU) eta *Ortugurencho* (1967) BUA, CE). Ahozko transmisioan, *Órtuntxo* forma erabiltzen dute auzotarrek.

Jatorrizko baserria zaharragoa zen, baina gaur egun dagoena 1946an berregindakoa da, inskripzio batek ondo adierazi moduan. Pisu bi eta ganbaradun etxea da, ondoan beste eranskin bat daukana. Etxea bera oso modu orekatuan dago antolatuta. Lehenengo bi solairuak, hiru ardatzen arabera antolatu dira, hau da, sarrerako atea erdian eta alboetan leiho bana. Goikoan, eskema bera jarraitzen da, baina hormigoizko balkoia duela erdian. Eskumako eranskinean egurrezko dintela duen atarte bat dago, eta gainean, lerrokatu barik, balkoia.

Baserria jasotzeko materialtzat harria erabili zuten, eta harlangaitza, aldiz, hormetan, juntura markatuekin; harlanduaz baliatu ziren, azkenik, kantaletan. Aparte aipatzekoak dira leihoburuak, dobelekin eginak. Bi isurkitako teilatuak babesten du etxea, eta ardatza albo batera dauka. Etxearen eskemak XVIII. mende amaierako ohiko egiturari erantzuten dio, baina inskripzioak argi uzten du noiz konpondu zen: *"REEDIFICADO / POR / PEDRO ARIÑO/ Y / LUISA LOROÑO / CONSORTES/ AÑO 1946 / ORTUGURENTXO"*.

toponimia

*Ortuaren oparitasunaz hitz egin dugu* Ortuguren *sarreran (***Ikus Ortuguren***). Edertasunez edo oparitasunez aparte, kasu honetan ulertu behar dugu etxe honek ondoan zegoen* Ortuguren *baserriarekin lotura izango zuela. Horrela gerora egindako etxeari txo txikigarria gehitu zitzaion, bertako etxe txiki zela adierazteko.*

# Pastoriena etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Pastóriena



*43° 11' 23"* *2° 35' 15"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*Andikoaparizio* (**Ikus Andikoaparizio**) baserriaren "*Landa*" izeneko soroan egindako etxea dugu. Baserri horren izenaren jatorriari dagokionez, etxearen jabe den familiaren goitizenetik dator. Gaizkak, *Pastoriena* etxearen jabeak, *Andikoaparizio* baserrikoa zuen aita, eta bera artzaina zen lanbidez, aita moduan. Auzokoen artean, *Andikoaparizio* etxea ere, noizbait, "*Pastoriena*" izenez ezagutu izan da. Horri jarraituz, eraikin berriari izen hori jartzea erabaki dute.

2011. urtean amaituriko etxebizitza da. Bera egiteko inspirazioa XVII. mendeko baserrietan dago, hau da, hiru gorpuzdunetan. Etxe asimetrikoa da, bi isuritako teilatuduna. Ezkerraldean, bi leiho ditu pisu bakoitzeko, eskuma aldean bakarra den moduan, eta beheko solairuan soilik. Tartean atartea dauka eta gainean, egurrezko balkoia, zeinera zabaltzen diren bi leiho luze. Hormak luzitu eta pintatuta ageri dira, kantalak harrizkoak dira eta ate eta leihoburuak, egurrezkoak. Zokalo gisa, harlangaitza erabili zuten.

toponimia

*Nahiz eta euskarazko hitz ezaguna* artzain *izan* pastore *ere erabili izan da Bizkaian eta, esaterako,* Pastorekorta *toponimoa dugu. Badirudi* pastore *hau erabili izan zen* unai *hitzaren ordez, hau da basoan behiak zaintzen dituena ez ardiak.*



# Sagasti

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Sástei / Sástriko



43° 11' 29" 2° 35' 2" *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Andikoako Goierria eta Besoita etxe multzoa lotzen duen errepidearen ondoan, eraikitako txaleta daukagu. *Sagastiorpo* izeneko lurretan egina zen, eta leku-izen horren lehenengo partea hartu da eraikina izendatzeko, *Sagasti* alegia. Auzotarren artean, *Sástei* eta *Sástriko* dira formarik erabilienak.

1985 inguruan jasotako etxe berria da, inguruko baserri-eraikuntzaren estiloari jarraituz egindakoa. Izan ere, fatxada nagusiaren tankerak XVII. mendean errotutako etxeak gogora ekartzen dizkigu. Isurki biko teilatuaren azpian hiru gorputz antzeman daitezke, erabateko simetriaz antolatuta. Alboetan, leiho bana dauka pisu bakoitzean, eta erdian, sarrerako atartea. Horren gainean, harkantoiek eutsita, egurrezko dintela du, adreiluzko hormari eusteko eta beste leiho bi eta imitazioko zurajea. Hormak luzituta eta pintatua dauzka, eta etxearen kantaletan zein atartekoetan, harlandua baliatu dute.

toponimia

*Hizkuntzaren aldetik azalpenik behar ez duen izena* sagasti *hitz arrunta baita. Garai batean sagarra elikagai garrantzitsua zen Euskal Herri atlantikoan oso iraupen luzeko janaria zelako. Sagarrak hartu eta gero bi eratara gordetzen ziren, ganbaran sikatzen utzita edo sagardo moduan, sagardoa ez baitzen edaria, "janaria" baizik. Ezin dugu aipatu gabe utzi Lizardik 1932an emandako poema zatia:* Sagasti berri, sagasti zuri, / inguma-atsegintokia iduri, / elurte arian geldia*!*




# Sakristanekoa etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Sakrístanekue



*"... una casa titulada "Sacristancoa"... del barrio de Andicona de la anteiglesia de Berriz... consta de piso llano destinado a cuadra y de tejabana y horno accesorios por su lado Oriental; de piso principal con cocina, sala, dos cuartos y un departamento destinado a pajar y mide una planta solar de ciento cincuenta y tres metros cuadrados..."*
*DJE 7/176 or. (1905)*

*43°11'9"* *2°35'27"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*Andikoako Andra Mari* (**Ikus Andikoako Andra Mari**) ermitaren ondoan zegoen frontoiaren a-tzealdean kokaturik aurkitzen dugu *Sakristanekoa* etxebizitza. XIX. mendeko erdialdera agertzen zaigu erregistratuta lehenbizikoz, Berrizko Udalak egindako eraikin-erroldan: *Sacristan de Andicona* (1857, BUA, Viv). Jaso ditugun beste aipuak XX. mendekoak dira, eta horietan, kofradiari edo Amabirjiñari zegokion aipamena desagertzen da: *Sacristancoa* (1905, DJE, 7/ 176. or.), *Sacristaukua* (1910, BUA, RU) eta *Sacristanecua* (1967, BUA, CE). Auzotarren artean, *Sakrístanekue* forma erabiltzen dute ahozkotasunean.

Bi pisu eta ganbaradun etxea da. Behekoan korta kokatu zen eta gainean, etxebizitza. Erabilitako materiala harlangaitza izan zen hormak egiteko eta leihoak, ateak eta etxearen kantalak, ostera, harlanduaz burutu zituzten. Bi isurialde eta miru buztandun teilatua dauka, oso hegal zabalarekin, horretarako beharrezkoak izanik egurrezko besoak. Albo batean aterpea eta labea ditu itsatsita. Fatxada nagusia modu bitxian dauka antolatua, kortarako sarrera alde batean dagoen harrizko dinteldun ate batetik egiten delako eta etxekoa, berriz, harlanduz burututako harmailadun irtengune batetik. Azken hau, segurutik, etxea egin zenean baino beranduago egindako obra baten ondorio izanik, teilatuaren hegal zabala moduan, derrigorrezkoa zelako eskailerak babestea. Etxea XVIII. mende amaierakoa izan daiteke, XIX. mendean berrantolatua.

toponimia

*Etxe izen berria -eneko amaiera hartu baitu. XIX. mendea baina lehenagoko etxe izenean -ena erabiltzen zen inguru honetan baina XX. mendean, berriz, -eneko nahiz eta erredundantea izan.*



# Solozar

etxebizitza

Aldaerak: Amurizana
Ahozkoa:



43° 11' 28" 2° 35' 6" *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Alboan duen *Sagasti* (**Ikus Sagasti**) txaleta moduan, XX. mendeko 80ko hamarkadan dago eraikita txalet hau, Besoita alderantz doan bidearen behealdean. *Solozar* lurretan eraikitzean, modo zuzenean soroaren leku-izena aprobetxatu zuten eraikina izenda-tzeko.

Etxe berria da, nahiz eta baserri tradizionalen elementuak izan, oso era berezian erabili dira. Hala, pisu bi eta ganbaraduna da, fatxada nagusia guztiz simetrikoa daukana. Beheko pisuan ohiko hiru gorputzak dauzka: alboetako leihoak eta erdian, egurrezko dintelak eutsia, atartea. Goikoan, berriz, alderik aldeko balkoia, hormigoizko zorua eta egurrezko karelduna. Eta gorengoan, ganbaran, bi isuriko teilatuaren angelua aprobetxatuz, barneko balkoia. Hormak luzituta baditu ere, zokalo gisa eta kantal guztietan harlangaitza erabili dute eta leihoburu denak egurrezkoak ditu.

toponimia

*Aparteko azalpenik behar ez duen izena osagaiak gardenak direlako solo "ereiteko lur eremua" eta zahar. Solo Bizkaierazko hitza da eta soro, berriz, beste euskalkietan ageri dena. Nahiz eta gaur egun jende askok nahasi soroetan ereiten zen garia, artoa edo patatak eta baratzean, berriz, lapikokoak (indabak, porruak, piperrak...).*

# Uribelar

etxebizitza

Aldaerak: Uribelarrea
Ahozkoa: Urúbillar



43° 11' 7"   2° 35' 32"   Berriz Iruditan / J.A. Ramos

*"... una casería llamada Uribelar o Uribellar... de la barriada de Andicona jurisdicción de Berriz, es de una vivienda, ocupa una planta superficial de un área y diez y siete centiareas..." DJE 8/60 or. (1908)*

XVIII. mende hasierako Bizkaiko su-erroldan aurkitzen dugu baserri honen gaineko lehen aipamena: *Uribe Larrea* (1704). Jatorrizko forma horretatik abiatuta, 1745. urteko su-erroldan *Vribelar* era agertzen zaigu. Hortik aurrera, dokumentu gehienetan forma bera agertzen da: *Uribe Lar* (1803, BAHP, A72/9), *Uribelar* (1857, BUA, Viv) eta *Uribelar* (1905, BUA, 40). Hala ere, batzuetan *Uruvillar* (1866, DJE, 2/ 23. or.) eta *Urubillar* (1910, BUA, RU) moduan ere agertu izan da. Azken forma hori azken erroldetan jasotzen dena, *Urubillar* (1967, BUA, CE), alegia, dugu ahozkotasunean erabiltzen dena (*Urúbillar*).

Guztiz eraberrituta dagoen baserria da. Gaur egun oso fatxada ordenatua dauka simetria ardatzaren arabera, baina azkeneko erreformaren aurretik atartea bera alde batean zeukan, eta bestelakoa zen bere itxura. Dena den, baserriak pisu bi eta ganbara dauzka eta sarrera egurrezko dintelak eutsitako atarte baten bidez egiten da. Honen gainean egurrezko kareldun balkoia egin diote, bi bao batuz, eta alboetan, solairu bakoitzean, leiho bana. Ganbaran, leiho bakarra dauka. Materialari begiratu ezkero, harlangaitza da nagusi eta harlandua gorde zuten kantal eta bao guztietarako, eskumaldeko leiho berrian ezik, honetan zurezko dintela baitauka. Teilatua isuri bikoa da eta datatzekotan, XVIII. mendekoa dela esan daiteke.

toponimia

*Etxe honen aipamen zaharrenean* Uribelarrea *ageri da. Tamalez izena ez da berriro horrela agertzen eta ezin dugu jakin benetako izena ote zen edo eskribau batek egindako zuzenketa. Hala eta guztiz ere 1641ean Elorrion Martin Uribelarrea ageri da. Ondorioz, pentsa liteke izenaren bigarren osagaia larre eta artikulua dela. Uribe toponimoa oso arrunta da mendebaldena, besteak beste merindade zahar baten izena.* Uri *hitzaren esanahia argia da "hiri", baina sarritan, izen zaharretan, kasu honetan bezala, ez da hiribildua edo populatutako auzoa, etxe soila baizik. Bereaz badirudi "beheko etxea" esan nahi zuela izen honek. Hala eta guztiz ere, toponimian ageri den* -be *osagai hori "txiki" moduan ere itzuli izan da. Hori horrela balitz "etxetxu" izango litzateke esanahia.* Aldeko *hitzak ez du aparteko zailtasunik.*



# Uribelaroste

etxebizitza

Aldaerak: Goikolea
Ahozkoa:



*43° 11' 6"* *2° 35' 35"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*Uribelar* (**Ikus Uribelar**) baserriaren ostean egindako egurrezko etxea, *Andikoaparizio* (**Ikus Andikoaparizio**) baserriaren lurretan eraikia. Orain arte *Goikolea* moduan ezagutu izan da etxe hau, aurreko jabearen abizenarekin lotuta. Toponimia-ikerketaren ondorioz, lekuaren izena hartzea proposatu da, eta onartu dute; hortik datorkio *Uribelaroste* izena.

Bi pisuz osatuta dago, eta nagusiena goikoa da, bertan kontzentratzen direlako elementurik adierazgarrienak. Behean, fatxada nagusian, leiho txiki bi bakarrik dauden bitartean, goikoan etxe erdia balkoiak hartzen du eta baoen neurria ere bikoitza da. Gainera, materialetan ere nabari da, behekoa luzituta eta zurituta dago, eta goikoa, aldiz, gutxi landutako egur ilunaz estalita. Solairu bakoitzak berezko sarrera du, eta biak aldamen batean daude. Gora joateko, kanpoaldean dauden eskailerak erabili behar dira, balkoiarekin bat egiten dutenak.

toponimia

*Bizkaian ohikoa da etxe-izenen lehenengo osagaia lehendik zegoen etxe zaharragoa baten izena izatea, kasu honetan bezala.* Uribelar *etxearen ostean edo atzean eraikitako etxea dugu hau (***Ikus Uribelar***).*




# Zabaleta

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa:



*43° 10' 44"* *2° 35' 45"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Andikoa inguruan XX. mendearen azken laurdenean eraiki ziren txaleten artean, honako hau dugu. Gertu duen *Bilbatuazpikoa* (**Ikus Bilbatuazpikoa**) baserriaren lurretan eraikia.

1986an egindako etxea da, neurri ederrekoa. Elkarren ondoan dauden bi bolumenek osatzen dute, bata L formakoa da, hiru isurkiko teilatuarekin, eta bestea, bolumen luzekoa. Lehena harrizko zokalo baten gainean altxatzen da, eta fatxadak pintatuta ditu, leihoen pertsiana ilunekin kontrastea eginez. Efektu bera lortzen da bestean, baina isurki biko teilatua daukanez, frontoian egurrezko egitura imitatu zen.

toponimia

Zabal *hitzak adiera antzeko baina desberdinak ditu, toponimian arruntenak "handia" eta "laua" dira. Kasu honetan dugun eta atzizkiak ere esanahi bi ditu, leku adierazlea edo ugaritasuna. Beraz* Laua *edo* Lauak *moduan uler dezakegu izen hau.*



# Zalditurria (-a) etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Sálturri / Saltúrrixek

*"... la casa principal de Zalditurria de dos viviendas... situada en la barriada de Andicona de la Anteiglesia de Berriz ocupa con su tejabana contigua ciento cinco y cuarto estados cuadrados de planta solar... la vivienda del amo de la casa consta en su piso llano de zaguan, cocina, dos aposentos y cuadra en el piso principal de sala, tres dormitorios, carejo y pajar; en el segundo piso de sala, dos dormitorios y encima camarote. La habitacion del colono se compone en el piso llano de zaguan, cocina y cuadra; en el piso principal de dos dormitorios y pajar y sobre los dormitorios camarote..."*
*DJE 5/22 or. (1881)*

*"... la casería principal de Zalditurria, ocupa con su tejavana contigua, ciento cinco y cuarto estados cuadrados de planta solar... consta en su piso llano de zaguan, cocina, dos aposentos y cuadra; en el piso principal de sala, tres dormitorios, carrejo y pajar; en el segundo piso de sala, dos dormitorios, y encima camarote..."*
*JOU/ Eskriturak*



*43° 10' 46"* *2° 35' 23"* *Berriz Irudítan / J.A. Ramos*

Baserri honen gainean aurkitu dugun aipurik zaharrena 1704koa da, Bizkaiko su-erroldan *Zaldi Yturriaga* izeneko baserria aurkitzen baitugu Andikoan. Jatorriz, bizitza biko baserria zena, dokumentazioan, beti *Zaldiyturria* (1771, BAHP, A277/1. or.) eta *Zalditurri* (1881, DJE, 5/ 22. or.) aldaerez aurkitzen dugu. Ahozko transmisioan, aldiz, *Sálturri* izena erabiltzen da auzotarren artean. Herritarrek, askotan, etxe honi eta alboan duen eraikinari (**Ikus Zalditurrialdekoa**) erreferentzia egiteko *Saltúrrixek* izena ere erabiltzen dute.

Bizitza biko baserria da, bere itxurak ere, ezker-eskuma, ondo azaldu moduan. Isuri biko teilatua dauka eta hiru pisuz osatuta dago, teilatupekoa barne. Eraikitzeko erabilitako materiala harlangaitza da eta harlandua da kantaletan eta leihoetan ikus daitekeena, ganbara aldean ezik. Honetan horma luzituta dago eta bao guztiak aldenik alde zabaltzen den balkoira ematen dute. Beste bi pisuetako baoetan salbuespena lehenengo solairuko leiho luzea da, segurutik, ugazabaren etxeari zegokiona. XIX. mende hasierako baserria da.

toponimia

*Nahiz eta itxuraz zaldi hitza eduki, Zaldibar kasuan bezala zaldu dugu kasu honetan. Zaldu hitza latinetik hartu zuen euskarak eta erdaraz ere badago, soto. Biak datoz latineko saltus 'baso' hitzetik. Zaldu esaten zitzaien abereen babeslekurako baso txikiei, sarritan erreka ondoan zeudenak. Oso polita da 1074ean Nafarroako dokumentazioan dagoen aipua: Soto uno, que dicitur a rusticis Aker Çaltua.*





# Zalditurrialdekoa (-a) etxebizitza

Aldaerak: Zaldituriakzesoria
Ahozkoa: Saltúrrixek



43° 10' 46" 2° 35' 22" Berriz Iruditan / J.A. Ramos

*"... la casa accesoria o menor de Zalditurri de una vivienda renovada recientemente en parte... en la misma barriada de Andicona, ocupa cincuenta y cuatro y medio estados cuadrados de planta solar... se compone en su piso llano de zaguan, cocina, aposento y cuadra; en el piso principal de cuatro dormitorios y pajar, y encima desban..."*
*DJE 5/22 or. (1881)*

Egun bizitza bateko baserri hau lehen *Zalditurri* etxearen eranskin zen, eta horrela jasotzen da dokumentuetan: *Zulduiturria Accesoria* (1905, BUA, 40). Baserriko ganadua gordetzeko erabiltzen zen, eta 2004an, baserri erara zaharberritu zuten. Lehengo eraikinari goiko pisu bat gehitu zitzaion, eta teilatuaren orientazioa ere aldatu zuten. Horren aurrealdean baserriko labea aurkitzen dugu. *Zalditurria* baserriaren (**Ikus Zalditurria**) kasurako aipatu dugun moduan, auzotarren artean eraikin bi hauek *Saltúrrixek* moduan ezagutzen dituzte.

Gaur egun guztiz berriztatuta eta aldatuta badago ere, XIX. mende hasieran itxuratutako baserria da, eta garai hartatik hormak baino ez ditu kontserbatzen. Pisu bi eta ganbara ditu honek, eta egitura oso sinplea da. Erdian, atartea dauka, eta horren alboetan, leiho bana. Lehenengo solairuan, aldiz, leiho luzea dauka erdian, eta beste bi leiho aldamenetan; gorengo pisuan, azkenik, leiho bakarra. Erabilitako materiala harlangaitza da; baina harlanduaz baliatu ziren kantalak indartzeko, baita leiho ertzetan ere. Atartean eta horren gaineko balkoiaren dintelek dobelak dituzte. Isurki biko teilatuari miru-buztan deritzona gehitu diote.

## toponimia

*Bi izan daitezke etxe honen izenaren azalpenak bata itxuraz errazana zaldiaren iturria. Tamalez, oso zail da Euskal Herriko toponiman* zaldia *agertzea* behorra *baitzen erabiltzen zena (*Behobia, Beotegi...*). Beraz pentsa genezake Zaldibar izenaren kasuan bezala hemen ez dugula* zaldi *hitza* zaldu *baizik.* Zaldu *ez da egun euskaraz erabiltzen, baina latinetik hartu zuen euskarak eta erdaraz ere badago,* soto*. Biak datoz latineko saltus 'baso' hitzetik. Zaldu esaten zitzaien abereen babeslekurako baso txikiei, sarritan erreka ondoan zeudenak. Oso polita da 1074ean Nafarroako dokumentazioan dagoen aipua:* Soto uno, que dicitur a rusticis Aker Çaltua*. Kasu honetan aldekoa gehitu zitzaion izenari eta gero etxe izen bihurtu Bizkaiko ereduari jarraiki.*



# Zugatza

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Subétza

*"... la mitad de la casería rústica titulada de Zugaza... radicante en el barrio de Andicona de la Anteilgesia de Berriz, que comprende la mitad de la caseria que cae hacia el oriente, una planta solar con nclusion de su basurero de ciento sesenta y dos estados, que equivalen a seiscientos diez y seis metros cuadrados superficiales de area.."*
*DJE 1/93 or. (1864)*

*"...la mitad de la casería rústica titulada de Zugaza... radicante en el barrio de Andicona de la Anteilgesia de Berriz, que comprende la mitad de la caseria que cae hacia al poniente, una planta solar de sesenta y ocho estados o doscientos cincuenta y ocho metros cuadrados superficiales de area, con inclusión de su basurero..."*
*DJE 1/98 or. (1864)*



*43° 11' 18"* *2° 34' 59"* *Berriz Irudita n / J.A. Ramos*

Baserri honen gaineko lehen aipamenak XVIII. mendean ageri dira, Bizkaian 1704. urtean egindako su-erroldan, hain zuzen ere: *Zuaza*. Urte batzuk geroago, *Zugaza* (1734, BAHP, A427/32) izenez jaso zen, eta hortik aurrera, forma bera mantentzen da dokumentazio guztian, *Zugaza* (1825, PE/1825) eta *Zugaza* (1967, BUA, CE) ditugularik horren adibide. Berriztarren artean ahozko eran, *Subétza* moduan ezagutzen da.

Bizitza biko baserria da, alde bat soilik berriztatuta daukana. Garai desberdinetako zatiak ditu, zaharrenak izanik XVI. mendeko silarriak. Hala ere, etxearen tankera XVII. mendean errotutakoa da, bi gorputz aldamenetan eta erdian, egurrezko dinteldun atartea, zutiko eta guzti (hormigoizkoak, egun). Balkoietan ere material bikoizketa bera ematen da, hormigoizkoa, lehenengo solairuan eta egurrezkoa, ganbaran. Bere horretan kontserbatzen da etxearen sarrerako puntu erdiko harrizko arkua eta kortarako arku beheratuduna. Isurialde biko teilatua dauka.

toponimia

*Oso arruntak dira Euskal Herrian zuhaitzekin lotutako toponimoak eta hau dugu horietako bat. Batuan* zuhaitz *esaten bada ere Bizkaian "sugatz" erabiltzen da eta interesgarria da ikustea nola antzinako* -h *hori* -g *bihurtu zen. Aldaketa hori toponimo batzuetan ere ikusten da eta arrunta da dokumentazioan* Zuazo *edo* Zuazu *modan agertzen direnak ahoz* Subetzu *edo* Sugetzu *ahozkatzea.*

# Zitua

*Abaroa*

*Abaroetxebarria*

*Agirretxe*
*(Ikusi Olakueta auzunea)*

*Altzategi*

*Ametzua*

*Ametzualdekoa*

*Anporta*

*Arginzoniz*

*Arginzonizbeaskoa*

*Arginzonizbeaskoaldekoa*

*Arginzonizuriarte*

*Arriaga*

*Arriagaganekoetxea*

*Arriagagoxinakoa*

*Arriagaonaindia*

*Arriagarrementeria*

*Atsategi*

*Azpikoetxea*

*Barrainkuena*

*Bekoetxea*

*Belakortuzarra*

*Belakortu*

*Berrizbeitia*

*Berrizbeitialdekoa*

*Bitzabalondo*

*Donarioena*

*Done Petri Txiki*

*Eizkoa*

*Ereñaga*

*Ereñagaurrekoa*

*Errotazarra*

*Hormastegi*

*Izuntza*

*Izuntzabekoa*

*Izuntzadeskarga*

*Matzaga*

*Matzagabekoa*

*Matzagaganekoa*

*Olabarria*

*Olabarrietxebarria*

*Olakueta auzunea*

*Olazarra*

*Olazarbarria*

*Olazarrondo*

*Otsaita*

*Otsaitaldekoa*

*Otsaitabeitia*

*Padura*
*(Ikusi Olakueta auzunea)*

*Pedrojuanena*
*(Ikusi Olakueta auzunea)*

*Perdillatza*

*Sakona*

*Sakonabide*

*San Antonio*

*Sanantonioaurre*
*(Ikusi Olakueta auzunea)*

*Sanantonioetxebarria*
*(Ikusi Olakueta auzunea)*

*Txosnagoikoa*

*Urzabal*
*(Ikusi Olakueta auzunea)*

*Urzabalberrizbeitia*
*(Ikusi Olakueta auzunea)*

*Zubiazpikoa*

*Zubiganekoa*

*Zubitoeta*

# Abaroa (-a) desagertuta

Aldaerak: Abaroerrota
Ahozkoa: Abóro



43° 9' 59"    2° 35' 7"    Berriz Iruditan

*Zalduerrekaren* errekaren urak aprobetxatu zituen errota honen lehendabiziko aipu dokumentala 1704. urteko Bizkaiko su-erroldetan aurkitzen dugu, *Abaro*. Gerora dokumentazioan aldaketa gutxi jasan ditu izen honek, eta forma bera ageri da dokumentu desberdinetan: *Abaroa* (1789, BAHP, A324/4) eta *Aboro* (1967, BUA, CE). XX. mendeko azken hamarkadetan desagertutako eraikina da. Auzotarren artean, *Abóro* moduan ezagutu da.

*"... el caserio rústico de Avaroa, con su molino... radicante en la jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, y que consta su planta solar de ciento veinte y cuatro y medio estados, construido de cal y canto, y sus angulos, puertas y ventanas con piedra silleria, y el que está dividido para dos inquilinos comprendiendo una división en la planta baja, la maquinaria del molino, cocina y portalada, con un primer piso y desban, y la otra división en la planta baja, la cuadra con su primer piso en el que se halla la cocina con su desban, estando divididas las habitaciones con cerraduria a media asta, teniendo al frente de dicho caserio molino, un horno para servicio de ambos inquilinos..."*
*DJE 1/2 or. (1863)*

*"... la casa rústica molino titulada de Abaroa... situada en jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, y que es accesoria de la caseria principal de Abaroa, y comprende con sus franquicias y antusano ciento once estados cuadrados superficiales de planta solar, y la que se compone de sus correspondientes piso bajo principal y segundo piso o desban, componiéndose el piso bajo, de cocina, horno de cocer pan, sala para la maquinaria y cuadras, de piso principal, con sala y dos cuartos, y el segundo piso para desban, con pajar sobre la cuadra..."*
*DJE 2/71 or. (1867)*

toponimia

Abaro *hitz arrunta izan da eta zuhaitz txikiez osatutako basotxoa adiera du. Sarritan abereak bertara babes bila hurbiltzen dira.*



# Abaroetxebarria (-a) desagertuta

Aldaerak:
Ahozkoa: Abaroetxebárri



43° 10' 2" 2° 35' 6" Berriz Iruditan

Egun Eitua industrialdea denaren bihotzean aurkitzen ziren *Abaro* etxe hauek. *Abaro* baserri errotaren inguruan hainbat aipu ditugun arren, XVIII. mendetik abiatuta, eraikin honen inguruan ia aipamenik ez dago. XX. mende hasierako eraikina izango dela uste badugu, 1967ko eraikinen erroldan baino ez dugu dokumentatu *Aboroechevarri*. Auzotarren artean *Abaroetxebárri* da ahozko forma erabiliena. Egun desagertuta dagoen baserri hau gaur egun *Aboro* jatetxearen atzeko aldean kokatuta zegoen.

toponimia

Abaro *hitz arruntari (***Ikus Abaro***) jatorrizko* Abaro *etxetik bereizteko* etxebarria *gehitu izan zaio. Beraz, "Abaro guneko etxe berria" dela esan nahi du izenak.*

# Altzategi

etxebizitza

Aldaerak: El pastor del Gorbea
Ahozkoa: Txósna / Goiko Txósna




*43° 10'2"* *2° 35' 38"* *Berriz Irudiatan / J.A. Ramos*

Bilbo-Donostia trenbide ondoan kokatua dagoen eraikina dugu honako hau. Dokumentazioan agertzen ez bada ere, XIX. mende amaiera edo XX. mende hasierakoa dela esan daiteke. Jende guztiak *Txósna* moduan ezagutzen duen arren, XX. mende erdialdetik aurrera *El Pastor del Gorbea* izenarekin ezagutzen da baserri-taberna hau. Zeanuri aldeko artzain famatu batek erosi eta taberna martxan jarri zuenean hartu zuen egun mantentzen duen izen hori. Dena den, orduko jabego-eskrituretan *Altzategi* moduan dokumentatzen da, eta hortik datorkio izena.

Kolore biziko etxe honetan, harrizko hormak dituen eraikin bat sumatzen da, kantalak oso harlandu ederrez indartuta dituena, hormak luzituta dituen arren. Trenbidearen eta errepidearen artean kokatzen denez, estua eta luzea da. Lau isurkiko teilatua du, eta bi pisu ditu. Fatxada nagusiko baoak hiru ardatzetan ordenatu dira, atea erdian izanik, beranduagoko estalpe baten babesean. Neurri oneko leihoek XX. mende hasierako etxeak gogorarazten ditu.

toponimia

*Etxe izen honen osagaiak argiak dira,* haltza *zuhaitz izena* Alnus glutinosa *eta tegi atzizkia. Sarritan makal edo txopoek ordezkatu badituzte ere haltzak dira erreka ondoko zuhaitzak itsas aldeko Euskal Herrian baina gero eta urriagoak dira. Zuhaitz apal hau, aireko oxigenoa hartzen duenez lurrak aberasteko landatu izan da Europan, batik bat autobide edo harrobien inguruan. Ezaguna da zuhaitza Bereterretxeren kantuaren hasierarengatik:* Haltzak ez du bihotzik, ez gaztanberak hezurrik.



# Ametzua (-a)

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Amétzu

*"... la casería principal de Amesua... radicante en jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz... que comprende ciento diez y ocho estados y tercio, equivalentes a cuatro areas y cincuenta centiareas de cabida... la casa accesoria comprensiva diez y nueve y dos tercios estados o sean setenta y seis centiareas..."*
*DJE 3/110 or. (1872)*



*43° 10' 20"* *2° 35' 7"* *Berriz Ruditan / J.A. Ramos*

Bizitza bateko baserri honen lehendabiziko aipu dokumentala 1704. urteko Bizkaiko suerroldetan aurkitzen dugu, *Amezua*, alegia. Gerora dokumentazioan aldaketa gutxi jasan ditu izen horrek, eta forma bera ageri da dokumentuetan. Auzotarren artean, *Amétzu* moduan ezagutu da. Parean duen baserria, hasiera batean arnaga izandakoa, egun ere *Ametzua* izenez ezagutzen da (**Ikus Ametzualdekoa**). Hori dela eta, XX. mendeko aipuetan *Amezua* viejo (1910, BUA, RU) moduan ageri zaigu etxea.

Baserri-etxe handia da. Aurrean duen eranskinak itxura zeharo aldatu arren, XVII. mendean hedatzen hasi zen estiloan jasoa dugu: solairu bi eta ganbara, isurki biko teilatuaren azpian. Bistakoak dira etxea osatzen duten hiru gorputzak. Alboetakoak harrizkoak dira, harlandua erabili bazuten ere kantaletarako eta jatorrizko leihoetarako. Erdian atartea dago, egurrezko dintelak eutsitako gorputzaren azpian, eta horren gaineko material nagusia adreilua da, tartean egurrezko egiturarekin. Leihoak ere egitura horretara egokitzen dira, eta ganbarako balkoia ere bai, egurrezko euskarria eta ondoko etxearen burdinsare berdina daukana.

toponimia

*Bizkaiko haritzak bi multzotan banatzen dira. Handien eta lirainenei, izen zientifiko Quercus robur eta Quercus petraea dutenei, aretx deitzen diegu eta eredua da Gernikakoa. Txikiagoei eta azal lodikoei, berriz ametz esaten zaie (Quercus pyrenaica). Azken hauek gogorragoak dira eta leku lehorrago eta txarragoetan hazteaz gain hobeki jasaten dute sua. Hostoak oso bestelakoak dira; iletsuagoak izateaz gain oso nabarmenak baitituzte sartu-irtenak. Hitz horri ugaritasuna adierazten duen zu atzizkia eta artikulua gehitu zitzaion.*

# Ametzualdekoa etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Amétzu



43° 10' 19" 2° 35' 6" *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Bizitza bakarreko baserria, dirudienez *Ametzu* baserriaren arnagaren lekuan eraikitakoa XIX. mendean. Auzotarren artean ere, *Amétzu* moduan ezagutzen da. Egungo jabeek ez dakite ezer bigarren baserri honen jatorriaz, biak *Ametzua* direla diote. Gure ustez, askotan gertatu izan den moduan, jatorrizko arnagaren eraikina erabilita bigarren baserri hau eraiki zen, eta, horregatik, XX. mendean *Amezua viejo* (1910, BUA, RU) ageri zaigula biak bereizteko, horrek esan gura du beste eraikin berriago bat zegoela.

Etxe bihurtutako arnaga da, XIX. mendean eta XX. mende hasieran nagusitu zen estiloan, goranzko tendentzia igarriz, ondoko *Ametzua* etxean (**Ikus Ametzua**) ez bezala. Materialak ere, orduan erabiltzen zirenak ditu: harlandua, kantaletan eta bao-inguru guztietan, eta eskasagoa, hormetan. Fatxada hiru ardatzetan antolatu zen, bi isurkiko teilatuaren babesean. Beheko solairuaren erdian, dinteldun atea dugu, eta alboetan, leiho bana; gainekoan, berriz, leiho bana behekoekin lerrokatuta; eta goikoan, azkenik, leiho luzea erdian eta txikiagoak aldamenetan, teilatuaren okertasunari egokitzeko. Azken solairuko balkoi luzeak etxearen bertikaltasuna hausten laguntzen du. Hormigoia erabiltzeak, nahiz eta habeak egurrezkoak izan, beranduago burututako berrikuntza baten berri ematen digu.

toponimia

*Izen gardena baldin bada hau da horietakoa Ametzua (***Ikus Ametzua***) baserri izenaz eta aldekoa hitzez osatua.*



# Anporta

etxebizitza

Aldaerak: Anportako errota
Ahozkoa: Ánporta

*"... la casa molino denominada de Amporta, cuya planta solar con inclusión del estolde mide setenta estados, en jurisdicción de Berriz... contiene tres piedras de moler..."*
*DJE 6/163 or. (1892)*



43° 10'28" 2° 36'0" Berriz Irudìtan / J.A. Ramos

Baserri honi buruzko lehendabiziko aipu dokumentalak 1796an aurkitzen ditugu, *Amportia* (BAHP, A65/7.) eta urte horretako su-erroldan *Amportea*. Hortik aurrera, beti izen bera mantendu da aldaketa gutxi jasan dituelarik. Noizbehinka, *Molino Amportea* (1910, BUA, RU) moduan agertzen da. Ez dugu ahaztu behar *Arrierreka* ubidearen ondoan kokatuta dagoela, eta errota-ingurua dela; bertan, honako hauek aurkitu ditzakegu, besteak beste: *Erroteta* (**Ikus Erroteta**), *Errotazar* (**Ikus Errotazar**), *Olazarra* (**Ikus Olazarra**) eta *Olabarri* (**Ikus Olabarri**). Auzotarren artean *Ánporta* da ahoz-ko forma erabiliena.

Bizirik dirauen XVIII. mendeko errota da, XX. mendearen erdialdean egindako berriztatzelanen ondoren aldatuta badago ere. Oraindik bi errotarri mantentzen ditu, eta ehotze-lanetarako beharrezkoak diren ubidea eta andapara ere bai. Produkziorako eraikina izateak ziurrenik izango zuen bere eragina etxearen itxuran eta sarrera nagusia kokatzerakoan. Izan ere, alboko fatxadetako batean dago, eta horretan ere, alboan. Etxea xumea da, beheko solairuak harria bistan du, eta bestea luzituta dago. Leihoak ere hala ditu, goikoak zein behekoak. Baorik berezienak sarrerak dira, nagusia zein bigarren mailakoa, biak harlanduekin eginak. Hala ere, lehena da dotoreena, harkantoi eta guzti ateburuari eusteko.

toponimia

*Nahiz eta gaur egun etxeari* Anporta *esaten zaion dokumentazioa argia da eta errota honen jatorrizko izena, 1796tik dokumentatua* Anportia *da. Inguruko euskalkiaren kontrako bidea segitu zuen izen honek eta gero* Anportea *bihurtu zen eta, azkenik,* Anporta*.*





# Arginzoniz etxebizitza

Aldaerak: Arginzonizgoxeaskoa
Ahozkoa: Argínsonis / Argisúri



43° 10' 38" 2° 35' 49" Berriz Iruditan / J.A. Ramos

*"... la casería rústica titulada Arguinzoniz de Suso o gojeascoa... situada en la barriada de Eitua jurisdicción de la anteiglesia de Berriz, que comprende ciento ocho estados cuadrados superficiales de planta solar, y la que se compone de una vivienda con piso bajo a manera de entresuelo, y de piso alto con sus correspondientes pisos, cuadras, divisiones y habitaciones..."*
*DJE 2/63 or. (1866)*

Bizitza bakarreko baserri honen gaineko lehendabiziko erreferentzia 1668koa da, *Arguinzonis*, alegia (BAHP, A415/32.). Gerora, eta *Arginzoniz* izeneko beste baserrietatik bereizteko (**Ikus Arginzonisbeaskoa**, **Arginzonisbeaskoakzesoria** eta **Arginzonizuriarte**), "de *Suso*" edo "*Goxeascoa*" erantsi zitzaion: *Arguinzonis de Suso* (1704, Bizkaiko su-erroldak) eta *Arguinzoniz Goxeazcoa* (1825, PE/1825). Inguruko auzotarren artean, *Argínsonis* edo *Argisúri* izenak erabiltzen dira baserri hau identifikatzeko.

Etxean bi bolumen bereizten dira, baserri askotan bezala. Baina honetan bitxiena ez da berriena, gehienetan den legez, ostekoa baizik, zaharrena. Etxe berria 1986. urtean egin zuten inguruetako tradizioari jarraituz, hots, puntu erdiko arkudun atartea eta bina leiho aldamenetan. Bigarren solairuan, antolamendu bera, baina arkuaren gainean leiho luze bat zabaldu zioten, eta gorengoko solairuan, balkoi luze bat. Teilatuaren formari egokitzeko, txoritokiak dauzka frontoian eta izkinako leihoen ordez. Hareharrizkoak dira etxe berriaren kantalak eta beheko solairuko bao inguru guztiak. Etxe zaharra, berriz, XVI. mendekoa da, harlanduen trazak ondo baino hobeto frogatzen duen legez, iluna, bao gutxirekin, baina puntu erdiko arkudun sarrera bikainaz.

### toponimia

*Izen honen etimoa uste baino ilunagoa da. Sarritan uste izan da* hargin *hitza dugula oinarrian, baina Mitxelenak ez du hori uste eta* Arginzano *eta* Argiñano *deitura eta leku izenekin lotzen du. Gauzak horrela ezagutzen ez dugun* Arginzo *moduko izen bat dagoela pentsatu behar dugu eta amaierak,* -ano *kasuetan bezala jabetza adierazten duen atzizkia izango litzateke. Ahoz ez da n-ren galerarik jaso, euskaraz espero genezakeen bezala, baina Arginsuri ere esaten zaiola ikusita badirudi izen ofizialaren eraginez mantendu dela* -n *hori.*



# Arginzonizbeaskoa etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Arginzónis Beaskóa

*"... la casería rústica titulada Arguinzoniz veazcoa, situada en la barriada de San Pedro de la Anteiglesia de Berriz,... que comprende con inclusión de su casa accesoria, su antusano y terrenos que la circundan, trescientos seis estados cuadrados superficiales de cabida y la que se compone de dos viviendas..." DJE 1/129 or. (1865)*



*43° 10' 36" 2° 35' 47" Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Bizkaiko su-erroldetan aurkitzen ditugu baserri honen gaineko lehen arrasto dokumentalak 1704. urtean: *Arguinzonis de Yuso*. XVIII. mendearen zehar "*Yuso*" edo "*Iuso*" hitzak erabiltzen dira beheko baserria dela adierazteko. Gerora, XIX. mendean, ordea, "*Veazcoa*" eta "*Beascoa*" hitzak erabili dituzte: *Arguinzoniz Veazcoa* (1825, PE/1825) eta *Arguinzoniz beascoa* (1888, BUA, 38). Horrela mantenduko da XX. mendean zehar, eta egun ere izen horrekin ezagutzen da. *Arginzonisbeaskoa* da jatorrizko baserria, eta horrek aurrealdean eranskina zeukan, egun baserria dena (**Ikus Arginzonisbeaskoaldekoa**).

XVII. mendean zabaltzen hasi zen estiloan egindako etxea da, 1995ean berriztatu zutena. Bi isurkiko teilatua dauka, eta ohituraren kontra, teilatuaren gailurra ez du erdian, ezkerraldean baizik, alde hori eranskin batekin handitu baitzuten. Hala ere, hiru gorputzak nabarmenak dira, aldamenekoak irtenagoak, eta erdialdekoa, atartea daukana, egurrezko dintelaren gainean eraikita. Leihoen antolamendua egoera berrira egokitu diote guztiz, gailurraren araberakoa baita. Leiho guztiak, zaharrak zein berriak, harlanduz inguratuta daude, etxearen kantalak bezala. Ganbarako leiho baten hegian inskripzio batek zera dio: *"ARGUINZONIZBEASKOA / URIBEZUBIA TAR JESUS / 1995-AN-BERRIZTATUA"*.

toponimia

*Bizkaiko etxe izenak inongo luzeenak dira Euskal Herrian eta beraietan oinarritutako deiturak luzeenak ere badira. Arrazoia ulertzeko erraza da. Sarritan, Erdi Aroan etxe bat egon zen inguruan gehiago eraiki ziren eta guztiek gorde zuten jatorrizko izena etxe beraren izanarekin batera. Lehenengo eta behin auzoaren izena dugu eta gero etxearena: Zengoitatagoitia, Trañajauregia, Gazteluiturri. Kasu honetan Aginzoniz auzoko beheko etxea da. Beasko hitzak beko adiera du eta gaur egun erabiltzen ez bada ere antzina oso erabilia izan zen. Hitz honen osagaiak beko eta indarra ematen zuen -as dira. 1704ko baserri zerrendetan itzulita ageri da "de yuso" eta geroago veazcoa zein beazcoa moduan ordurako inguruan ez baitzen s eta z bereizten.*

# Arginzonizbeaskoaldekoa

etxebizitza

Aldaerak: Dukiena
Ahozkoa: Arginzónis Akzesória
Dukiéna



*43° 10' 34"* *2° 35' 47"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Bizitza bakarreko baserria, bana gaur egun bertan familia bi bizi dira egun. Hasiera batean, *Arginzoniz* (**Ikus Arginzoniz**) baserriaren eraikin gehigarria omen zen: baina, aspalditik, duela ehun urte baino gehiago, etxebizitza moduan erabilia izan da. Horrela, XX. mendeko dokumentazioan *Arguinzuis Accesoria* (1905, BUA, 40) eta *Arguinzoniz beascoa accesoria* (1967, BUA, CE) agertzen dira. Auzotarren artean, baserri hau *Dukiena* moduan ere ezagutzen da. Ezizen hori jabeen birraitonaren aitarengandik dator: antza, egunero Ereñako tabernara (**Ikus Ereñaga**) joaten zen, beste auzotarrak astean behin joaten ziren bitartean. Zalditegia ere izen horrekin ezagutzen da.

*Arginzonizbeaskoa* etxearen osagarri izan zena gaur egun baserri-etxe ederra bilakatu dute, berriztatze sakon baten ondoren. Eraikinaren itxura XIX. mendean zabaldu zena da: bi isurkiko teilatua, harlangaitza hormetan, eta harlandua atean eta lehenengo bi solairuetako leiho guztietan. Azkeneko pisuan, ostera, alderik alde doan egurrezko balkoia dauka, eta bertara zabaltzen diren leihoek egurrezko dintela daukate.

toponimia

*Arginzonizbeaskoa etxearen ondoan eraikitako etxea.*



# Arginzonizuriarte etxebizitza

Aldaerak: Froilanena / Uriarte
Ahozkoa: Arginzóniz uriárte / Udxárte
Uriárte / Fróillanéna

*"... la casería nombrada Arguinzoniz Uriarte... en el barrio del Oeste, de la anteiglesia de Berriz, se compone de dos viviendas, cuyas distribuciones son, en la vivienda del lado Sur y su piso llano, un zaguan comun a las dos viviendas, cocina, dos cuartos y cuadra, en el piso principal dos cuartos y cuadra y en el resto desvan y pajar, y sobre el cuarto en la planta central camarote. En la otra vivienda del lado Norte en el piso llano cocina, un cuarto y cuadra y en el piso principal dos cuartos, camarote y pajar, y encima de los cuartos camarote... caseta horno de pan cocer situada contigua y hacia Sur de la casa..."*
*DJE 6/75 or. (1892)*



*43° 10' 31"   2° 35' 50"   Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Egun hutsik eta erdi-erorita dugun baserri-etxe honen gaineko lehen aipu dokumentalak XVIII. mendean aurkitzen ditugu. 1704. urteko su-erroldan agertzen zaigun *Uriarte* izenak eraikin honi egiten dio erreferentzia. Gerora, dokumentazioan era bi tartekatzen dira: *Arguinzonis Uriarte* (1723, BAHP, A789/32) eta *Uriarte* (1857, BUA, Viv.). Auzotarren artean, aldiz, era desberdinak erabili izan dira baserria aipatzerako orduan: *Arginzóniz uriárte*, *Udxárte*, *Uriárte* eta *Fróillanéna*, jabearen erreferentzia egiten diona.

XVII. mendean oso hedatuta egon zen egitura badu ere, beste baserri batzuetan ikusten dugun ezaugarria dauka, hots, atartea alboan kokatuta izatea, XIX. mendeko handitze baten ondorioz. Jatorrizkoa garbia da. Hiru gorputzez osatuta zegoen. Aldameneko biek harlanduzko kantalak eta baoak zituzten, horma zuriekin kontrastea eginaz; eta erdiko atartea burutzeko, egurrezko dintela erabili zuten eta eusteko, oso zabala zelako, harrizko oina eta egurrezko zutikoa. Gainean, zurezko egitura zeukan, harlangaiz arineko tarteekin, eta egurrezko leihoekin. Baliteke bizitza biko baserri bihurtzeko lanak egin zituztenean, etxea eskuma aldean zabaltzea, gailurra ere mugituz eta bakoitzari ganbara aldean balkoi bana ematea.

toponimia

*Bizkaiko etxe izenak inongo luzeenak dira Euskal Herrian eta beraietan oinarritutako deiturak luzeenak ere badira. Arrazoia ulertzeko erraza da. Sarritan, Erdi Aroan etxe bat egon zen inguruan gehiago eraiki ziren eta guztiek gorde zuten jatorrizko izena etxe beraren izanarekin batera. Lehenengo eta behin auzoaren izena dugu eta gero etxearen berarena: Zengoitatagoitia, Trañajauregia, Gazteluiturri. Kasu honetan* Aginzoniz *auzoko etxeen artekoa da* Uriarte. *Uri hitzak adiera bi ditu "hiribildua", Durango edo Ermua bezala, eta gaur egun galduta dagoen "etxea". Erdaraz ere gauza bera gertatzen da eta* villa *hitzak adiera bi hauek ditu. Beraz, gaur egun Etxearte esango genuke gauza bera esateko.*

# Arriaga

etxebizitza

Aldaerak: Arriagaetxenagusia
Ahozkoa: Árrixa / Arréilla



43° 10' 10" 2° 35' 39" Berriz Iruditan / J.A. Ramos

*"... la casería rústica titulada Arriaga... situada en jurisdicción de la anteiglesia de Berriz, que comprende con su tejabana y franquicias sesenta estados equivalentes a doscientos veinte y siete metros cuadrados de cabida, y la que se compone de sus correspondientes divisiones y habitaciones..."*
*DJE 2/184 or. (1868)*

*"... la casería rústica titulada Arriaga-Echenagusia... del barrio de Eitua de la anteiglesia de Berriz... se compone de piso llano con zaguan de entrada, dos cocinas, dos cuartos, cuadras y una tejavana horno por el exterior en el ángulo Sudeste, de piso principal con dos cuartos y pajar y encima en la parte centrar camarote: mide su planta con inclusión del horno trescientos cuarenta y cuatro metros..."*
*DJE 6/95 or. (1892*

Arriaga etxe-multzoan nagusia dugun baserri honen gaineko aipuak Bizkaiko su-erroldetan aurkitzen ditugu: *Arriaga* 1704an eta *Arriaga Echenausia* 1796an. Gerora, dokumentu guztietan izen biak uztartu egin dira: batzuetan, *Arriaga* agertzen da, eta beste batzuetan, aldiz, izen konposatu gisa, *Arriaga Echenagucia* (1892, DJE, 6/ 99. or.) kasu. 1859ko izendegian, ostera, etxe-multzo guztiari erreferentzia egiten dion *Arriágas* izena aurkitzen dugu. Berriztarren artean, *Árrixa* edo *Arréilla* moduan ezagutzen da baserri hau.

Baserri barroko ederra, aldaketa txikiren bat jasan duena, ezkerraldean igartzen den harri taiuketak edo balkoi erako leiho luzeak adierazi moduan. Fatxadaren antolamendua garbia eta guztiz simetrikoa izango zen. Harlandua erabili zuten etxearen kantal eta bao guztietan, oso kalitate oneko hareharria. Erdian, atartera sartzeko arku bikaina; eta alde banatan, leiho bana. Lehenengo solairuan, erdialdean, beste bi leiho zituen (bat, balkoi bihurtua beranduago); eta aldamenetan, txikiagoak, teilatuari egokitzeko, txikia den moduan ganbaran dagoena. Bi isuritako teilatua dauka.

toponimia

*Izen gardena, eta Euskal Herria menditxu honetan ugaria, leku askotan ageri baitira harriak. Ondorioz deitura moduan ere zabala izan da. Osagaiak* harri *eta* -aga *leku-atzizkia.*



# Arriaganekoetxea (-a) etxebizitza

Aldaerak: Arriagaganekoa
Ahozkoa: Báldarrena

*"... la casería rústica titulada Arriaga Goyena ..." DJE 2/191 or. (1868)*



*43° 10' 12"* *2° 35' 27"* *Berriz Irudītan / J.A. Ramos*

Bizitza bateko baserri honen gaineko lehendabiziko arrasto dokumentala 1729koa da, *Arriaga Ganecoechea* (1729, BAHP, A611/31), alegia. Hortik aurrera, XIX. eta XX. mendeetan zehar, aldaera desberdinak izan ditu izenak: *Arriaga goxeascoa* (1825, JCR 0571/014), *Arriaga goicoa* (1825, JCR 0571/012), *Arriaga Goyena* (1882, DJE, 5/ 54. or.), *Arriaga Gainecua* (1905, BUA, 40) eta *Arriaganecoa* (1967, BUA, CE). Auzotarren artean, *Baldarrena* moduan ezagutzen da. Irene Gaztelurrutiak haren aitonari entzundakoaren arabera, lehen etxe horretan gizon nahiko baldarra bizi zen, eta hortik datorkio etxeari ezizena.

Baserria aspaldi dokumentatzen bada ere, gaur egun ikusten duguna XX. mendearen hasieran orduko ohiturari jarraituz berriztatu zuten eraikina da. Oso modu sinplean atondu zuten fatxada nagusia, bi solairuei eta ganbarari guztiz egokitua. Erdian atea dauka, eta horren alboetan, leiho bana: lehenengo solairuan, beheko baoekin lerrokatuta, beste leiho bana dago, eta ganbaran, fatxadaren erpinean, leiho txiki bat. Bai hormak, bai etxe-kantalak eta bao-inguru guztien moldurak, luzituta eta pintatuta daude. Teilatua hiru isurkikoa da.

toponimia

*Bizkaiko etxe izenak inongo luzeenak dira Euskal Herrian eta beraietan oinarritutako deiturak luzeenak ere badira. Arrazoia ulertzeko erraza da. Erdi Aroan etxe bat egon zen inguruan gehiago eraiki ziren eta guztiek gorde zuten jatorrizko izena etxe beraren izanarekin batera. Lehengo eta behin auzoaren izena dugu eta gero etxearen berarena: Zengoitatagoitia, Trañajauregia, Gazteluiturri. Kasu honetan* goiko aldekoa *dela esaten digu, baina interesgarria da hori esateko euskaldunek ditugun eta eduki ditugun bideak. Lehenengo aipuetan* Arriagaganekoetxea *ageri da, geroago, laburragoa den* Arriagaganekoa *eta XIX. mendean beste hiru aukera desberdin:* Arriagagoxeaskoa, Arriagagoikoa *eta* Arriagagoenengoa*. Euskaraz izan diren aukeren artean bakarra falta da* Arriagagoitia*.*

# Arriagagoxinakoa (-a) etxebizitza

Aldaerak: Arriagagoxinaga / Ubillena
Ahozkoa: Ubíllena / Kósiñengue



43° 10' 11" 2° 35' 33" Berriz Iruditan / J.A. Ramos

*"... la casería rústica titulada Arriaga-gojina... situada en la cofradía o barriada de Eitua jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende sesenta y uno y cuatro estados, equivalentes a doscientos treinta y tres metros cuadrados de cabida, y la que se compone de piso bajo con portalada, cocina, un dormitorio y cuadra, de piso segundo con un dormitorio, salon y pajar, y de piso tercero de desban y pajar; y de un horno contiguo a la misma caseria, que comprende dos y medio estados..."*
*DJE 2/191 or. (1868)*

Baserri honen gaineko lehendabiziko arrasto dokumentala 1745eko Bizkaiko su-erroldakoa da, *Goxina*, alegia, eta hortik aurrera, aldaera desberdinak ezagutu ditu: *Arriaga Goxinacoa* (1825, PE/1825), *Goxiñacóa* (1859, BUA, Nmcr), *Arriaga-Gojina* (1869,DJE, 2/ 191. orr), *Goxinaga* (1876, DJE, 3/ 110. orr), *Goxinena* (1892, DJE, 6/ 99. or.), *Arriagagoxinaga* (1967, BUA, CE). Auzotarren artean, *Ubillena* moduan ezagutzen da. Lehen etxe horretan bizi zen gizon bati jarritako ezizena ei da.

XVII. mendean zabaldu zen egitura dauka, baina bere altuerak eta lehenengo solairuko leihoen neurriak XIX. mendean, behintzat, egindako erreforma baten berri ematen digu. Hala, ohiko hiru gorputzak bereizten dira, harrizkoak, aldamenekoak; eta erdikoa, egurrezko egitura eta adreiluduna, kolore bizikoa, atartearen gainean. Lehenengoetan, harlangaitza erabili zuten hormetan eta harlandua, kantal eta leiho inguruetan, azpimarragarria izanik eskuma aldeko beheko solairuko leihoaren neurri eskasa. Azpimarragarria den moduan, erdialdeko adreiluzko hormarekin kontaktuan dagoen kantaletako harria kareharria izatea, beranduago egindakoaren seinale. Erdialdeko gorputzari egurrezko dintelak eusten dio, janbetako inpostaren gainean. Lehenengo solairuan zabaldu diren leihoak handiagoak dira, pintaturiko plaka batek atonduak, eta frontisekoak, ostera, egurrezkoak, zurajean ondo txertatuak. Gainean, tartekatuta, adreiluzko 22 txoritoki ikus daitezke. Isurialde biko teilatua dauka, hegal zabalekoa eta, horrelakoetan egiten zen moduan, eusteko egurrezko besoak erantsi zizkioten.

toponimia

Arriagaganekoetxea *sarreran esandakoari (***Ikus Arriagaganekoetxea***), kasu honetan gehitu behar diogu* Goxina *da etxearen benetako izena eta oso gutxitan ageri da* Arriaga *izenaz lagunduta. Beste guztiak ez bezala esangura iluna du baina ez dirudi* osin *hitzarekin zer ikusia duenik. Hasieran* Goxina *bazen ere berehala bihurtu zen* Goxinakoa *eta XIX. mendean herri-etimologia dela medio* Gojenaga*. Ahoz, inguruan arrunta den bezala hasierako G*-ren *ordez* K- *ahoskatzen da.*



# Arriagaonaindia (-a) etxebizitza

Aldaerak: Onandia
Ahozkoa: Á Ónaindi / Onándi

*"... la casería rústica titulada Arriaga Onandia, radicante en el barrio de Eitua en la anteiglesia de Berriz,... se compone de piso llano con zaguan, dos cocinas y cuadra, y además una tejabana aditamento por el lado Norte y horno por el lado Sur; de piso principal con dos cuartos y sala, y el resto pajar y camarote, y mide una superficie de doscientos treinta y un metro cuadrados con inclusión de la tejabana y horno..."*
*DJE 6/99 or. (1892)*



*43° 10' 12"* *2° 35' 23"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Arriaga inguruan aurkitzen den bizitza bakarreko baserri honen inguruan bildu ditugun lehen aipuak Bizkaiko su-erroldetan jasotzen dira, eta, horrela, 1745. urtean *Arriaga Onandia* izena agertzen zaigu. Gerora, dokumentazioan aldaketa gutxi izan ditu izen honek: dena jarraian, hau da, *Arriagaonandia* (1825, PE/1825) edo banatuta, hots, *Arriaga Onandia* (1910, BUA, RU) agertzea izan da ñabardura bakarra. Horrelako izenekin normalean gertatzen den bezala, kasu honetan ere ahozko transmisioan izenaren bigarren osagaia bakarrik erabiltzen da: *Ónaindi* edo *Onándi*. Auzotarrek, ordea, ez dute Arriagaseko *Onaindi* baserria dela bereizteko beharrik ikusten.

XVII. mendean hedatu zen trazan eraikitako baserria da. Hiru gorputzez osatutakoa, erdiko atartea antolotzaile delarik. Alboetako bi gorputzak harrizkoak ditu, silarriak kantaletan eta leihoetan dauzka, bana, solairu bakoitzean. Eta erdian, ohitura den bezala, harrizko janben eta harkantoien gainean egurrezko dintelak eusten dio horma arinagoak dituen erdialdeko gorputzari. Honetan, lehenengo solairuan leiho bat zabaltzen da eta ganbaran, txikitxo bi. Bi isurialdeko teilatua du eta, beheko solairuan ezik, hormak luzitu eta pintatuta dauzka.

toponimia

*Arriagaganekoetxea sarreran esandakoari (**Ikus Arriagaganekoetxea**), kasu honetan gehitu behar zaio "alde honetan" dagoela esan nahi du onandi eta harandiren kontrakoa da. Herri etimologiek ona eta handirekin lotu badute ere azalpen horiek ez dute ez hanka ez buru.*

# Arriagarrementeria (-a) etxebizitza

Aldaerak: Txuriona
Ahozkoa: Txúridxona / Txúbidxona



43° 10' 10" 2° 35' 37" Berriz Iruditan / J.A. Ramos

*"... la casería llamada Arriaga-Rementeria, en la barriada de Eitua, jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz... ocupa su planta solar ciento noventa y siete metros cuadrados... se compone en su piso llano de zaguan, cocina, aposento, horno y cuadra; en el piso principal, de dos dormitorios y pajar, encima de los dormitorios camarote..." DJE 5/54 or. (1882)*

Baserri honen gaineko lehen aipu dokumentala 1791. urtean aurkitzen dugu: *Arriaga Rementteria* (1791, BAHP, A443/33). Ordutik, aldaketa barik mantendu da izen bera, eta horrela, Udaleko azken erroldan, *Arriagarementeria* (1967, BUA, CE) aurkitzen dugu. Auzotarren artean, *Txúridxona* moduan ezagutzen da baserri hau.

Bi isurkiko teilatuaren azpian baserri handi bat dago, duela mende erdi bat bi etxebizitzatan banatu zena. Aurretik ere izan zuen aldaketarik, ezkerraldea jaso egin baitzioten, baita teilatuaren gailurra mugitu eta etxearen ardatza aldatu ere. Fatxadaren elementurik aipagarrienak sarrerako arkua, XVIII. mendeko estiloan egina, eta eskumako leihoak dira, harlandu ederraz inguratuak. Kantaletakoak ere halakoak dira. Hormak, ostera, harlangaitzaz jaso zituzten, eta, berez, luzituta eta pintatuta egongo ziren. Lehen aipatu ditugun harrizko leihoak izan ezik, beste guztiak egurrezkoak dira edo luzituta daude, eta ez daude modu uniformean antolatuta, etxea handitu zeneko garaiaren adierazle. Hormigoizko balkoia ere tenore berekoa da.

toponimia

Arriagaganekoetxea *sarreran esandakoari (***Ikus Arriagaganekoetxea***), kasu honetan* "errementariaren" *etxea dela adierazten digu izenak.*



**Nuévo Nomenclátor**

**Provincia de Vizcaya** — **Partido judicial de Durango**

**Ayuntamiento de Verriz**

| Nombres de las poblaciones y viviendas | Clase de las mismas | Distancia a la cabeza del Ayuntamiento |
|---|---|---|
| Abaroa | Casa de labor | 700 metros |
| Amézua | Casa de labor | 1 kilometros |
| Amportéa | Molino | 2,700 metros |
| Arguinzoniz | Casa de labor | 2,900 metros |
| Arriágas | Casas de labor | 2 kilometros |
| Azategui | Casa de labor | 2,770 metros |
| Belacórtus | Casas y molino | 1,600 metros |
| Berrizbéitia | Casa de labor | 450 metros |
| Donarioéna | Casa de labor | 1,388 metros |
| Eízcoa | Casa de labor | 1,440 metros |
| Eréñagas | Casas y venta | 2,200 metros |
| Errotásárra | Casa de labor | 2,777 metros |
| Hormástegui | Casa | 380 metros |
| Yzunzas | Casas de labor | 2,300 metros |
| Mázagas | Casas de labor | 500 metros |
| Ochaítas | Casas de labor | 1,388 metros |
| Olabarrías | Casas de labor | 3 kilometros |
| Olaldea | Casa de labor | 2,780 metros |
| Olázarco-errotéa | Molino | 2,780 metros |
| Padúra | Herrería o fragua | 550 metros |
| Perdiláza | Casa de labor | 2 kilometros |
| Sacóna | Casa de labor | 1,800 metros |
| San Fausto | Hermita | 1,388 metros |
| San Pedro | Hermita | 2,100 metros |
| Zubiaspicóa | Molino | 1,450 metros |
| Zubiganecóa | Molino | 1,380 metros |
| Zubitoéta | Casa de labor | 1,390 metros |

*BUA / Udal izendegia, 1859.*





# Atsategi

etxebizitza

Aldaerak: Atsategibarria
Ahozkoa: Atsátei



43° 9' 60" 2° 35' 41" Berriz Irudítan / J.A. Ramos

*"... la casería rústica titulada Azategui... situada en la Cofradía de Abaitua barrio de Arriaga jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que ocupa una planta solar de ochenta y dos y cuarto estados cuadrados o sean trescientos doce metros y cochocientos setenta y nueve milésimas de metro, y la que se compone en su piso llano de zaguan, enlosado, cocina, horno, aposento y dos cuadras, y encima de este piso, de tres dormitorios, desban y pajar, siendo su construcción de piedra mampostería y silleria por sus cuatro fachadas hasta el tejado, los suelos de los dormitorios y del desban entablados, las cerraduras del zaguan de mampostería y el resto de la casa de tabiques de ladrillo, y la armadura de material de roble..."*
*DJE 1/107 or. (1864)*

Jatorrizko baserriaren gaineko lehen aipu dokumentala 1704ko Bizkaiko su-erroldetan aurkitzen dugu, *Asategi*, hain zuzen ere. XIX. eta XX. mendeetan zehar, aldaketa gutxi jasan ditu izen honek: *Asattegui* (1800, JCR 1128/017), *Azategui* (1859, BUA, Nmcr), *Atzategui* (1910, BUA, RU.) eta *Atzategui* (1967, BUA, CE.). Baserria orain dela urte batzuk bota zuten, industria-gune berria egiteko. Dena den, egungo txaleta 1973. urtean eginda dago. Abadiñon izen bereko baserri bat dago, eta 1796ko su-erroldan *Berriz Asategui* aipua agertzen da, Abadiñoko *Asategui* etxetik bereizteko. Ahozko transmisioan *Atsátei* aldaera mantendu da, eta, egun, txalet honi erreferentzia egiteko *Atsategibarria* ere erabiltzen da.

Jatorrizko baserria bizitza bikoa zen, eta hortik 1905. urtean Berrizko Udal Artxiboen dokumentazioan aurkitzen ditugun aipuak: *Azategui Juliana* (1905, BUA, 40) eta *Azategui de José* (1905, BUA, 40). Aipamen horiek, gure ustez, erakusten

toponimia

*Dokumentazioan z eta s tartekatzen dira baina ahoz* Atsatei *esaten zaionez badakigu, ia ziurtasun osoz, jatorrizko izena* Atsategi *zela. Bizkaian oso arrunta da toponimo batean -ts soinua zegoen kasuetan z edo s agertzea idatzirik. Pentsa genezake kasu honetan* atso *hitza eta tegi "etxe" atzizkia ditugula. Gogoratu behar da hitz konposatuetan* -o>-a *aldaketa ohikoa dela eta, esaterako,* pagadi *esaten diogula pago asko dagoen lekuari.*





*Gerediaga Elkartea / T. Angoitia*

dute bertan familia bi zeudela. Desagertuta badago ere, XIX. mende amaierako eta XX. mende hasierako etxe neoklasiko bikoitzaren adibide garbia zen. Guztiz simetrikoa, horma luzitu eta pintatuekin, eta baoak harriz inguratuak. Hiru solairu eta ganbara zuen eta etxe bizitzen arteko banaketa bistakoa zen. Alde bakoitzaren baoak hiru ardatzetan atondu ziren, erdikoak balkoiak izanik lehenengo eta bigarren solairuetan. Leiho txikienak ganbarakoak eta bigarren pisuko izkinakoak ziren.

Honen ordez egin zen etxe berria, ostera, bizitza bakarrekoa da. Etxea lehenengo solairuan altxatzen da. Behekoan, sarrera, garaje eta soto funtzioa egiten duena dagoelako, baita aterpea ere, harrizko zutikoen gainean. Aurreratutako gorputzak du indarra. Harlanduzko zutoinak markatuta, balkoiak zeharkatzen du alderik alde. Eta ondoan, imitazioko zurajea egin zioten, tarteak zuritu egin zituzten eta goialdekoak, adreiluaz bete. Besteetan ere konbinazio bera erabili zuten.





# Azpikoetxea (-a) etxebizitza

Aldaerak: Gallegoena / Arriagazpikoa
Ahozkoa:



*43° 10' 11"* *2° 35' 27"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*"... la casería titulada Arriaga-azpicoa ó Azpicoechea en la cofradía de Eitua de Berriz,... que es de una vivienda, ocupa con el horno y antusano una plant solar de ochenta y siete estados veintiséis pies, equivalentes a tres areas y treinta y tres centiareas..."*
*DJE 6/7 or. (1891)*

Eraikin berri honek egun XIX. mende amaieran desagertutako baserriaren lekuan eraikita dago, eta hortik datorkio izena. Aipatu dugun jatorrizko baserri honen gaineko lehen aipamenak XVIII. mendean jasotzen dira: *Arriaga Azpicoa* (1779) BAHP, A390/2). Dena den, dokumentazioan *Arriagazpikoa* baino, *Azpicoechea* (1825, PE/1825) da gehien agertzen den izena. Eraikin honi arrastoa galtzen diogu XX. mendean. Erreferentzia faltak garai horretan desagertu zela pentsatzera eraman gaitu.

Azken urteotan Udalak abian jarritako ikerketa toponimikoaren harira, eraikin berri honek desagertutako baserriaren izenarekin erregistratzea erabakia hartu da. Eraiki zenetik, alegia, *Gallegoena* moduan ezagutu izan da, familiaren jatorria dela eta.

Lehengo baserri baten inguruan egindako txaleta da, 1995ean, tradizioari keinu eginaz. Izan ere, harria erabili zuten lehenengo solairua forratzeko, leihoen ertz guztiak, kantalak eta, gainontzekoetan, horma pintatuak. Guztia, isurialde biko teilatuaren azpian.

toponimia

*Aparteko azalpenik behar ez duen izena. Hala ere Bizkaian eta bereziki Durangaldeko usadioan ohikoa da horrelako izenen aurrean auzo izena jartzea Zengotitabengoa izenean bezala.*



# Barrainkuena

etxebizitza

Aldaerak: Zubiaurre / Gomendiozubiaurre
Ahozkoa: Bárrenkuna / Bárrenkune

*"... la casería rústica titulada Barraincuena... situada en el barrio de Eitua jurisdicción de la anteiglesia de Berriz, que contiene un area de setenta y tres estados, y se compone de piso bajo, alto y camarote..."*
*DJE 1/35 or. (1863)*



*43° 9' 53"* *2° 34' 34"* *Berriz Irudītan / J.A. Ramos*

Baserri honen lehendabiziko aipu dokumentala 1770ekoa da, hots, *Barracaicuena* (1770, BAHP, A134/1.). 1796ko su-erroldetan, bestalde, *Barraincoa* moduan agertzen da, eta urte berean, berriz, *Zubia Barrencuena* (BAHP, A571/33.) aldaera. Aurretik ere, *Gomendio Zubiaurre Barrainguena* (1773, BAHP, A509/1. or.) moduan topatzen dugu dokumentazioan. 1857tik aurrera, *Barrancuena* (1857, BUA, Viv.) izena nagusitzen da dokumentazioan, eta azken Udal-erroldaren aipamena ere ildo horretatik doa: *Barraincuena* (1967, BUA, CE.). Auzotarren artean, ahozko transmisioan *Bárrenkuna* eta *Bárrenkune* erabiltzen dute.

Gaur egun daukan itxuraren atzean, aspaldiko baserriaren tankera ezkutatzen da. Argazki zaharretan ikusten denarekin konparatzen badugu, XVII. mendean zabaldu zen estiloa antzeman daiteke. Hiru gorputzez osatutakoa zen. Beheko solairua harrizkoa zuen, harlandua zuen kanpoaldeko kantaletan eta alboetako leiho-ertzetan, eta harlangaitza, aldiz, hormetan. Ez zuen eta ez du erdiko atarterik, eta horren lekuan atea dauka alde batean, hori izanik ziurrenik beranduago egindakoaren seinale, XVIII. mende bukaeran behintzat.

Gaineko solairuak egurrezko egituraz armatutakoak ziren, tartean adreiluzko hormak dituelarik. Lehenengo solairuan hiru leiho zituen: gorputzeko bana. Ganbaran, alderik alde doan balkoi bat dauka. Azkeneko berriztatzean, baoak lehen moduan utzi dituzte, eta hormak luzitu badituzte ere, harlandua ez dagoenetan harria imitatuz pintatu dituzte kantalak, eta dagoenetan, dinteletan dobelak imitatzen saiatu dira.

toponimia

*Baserri izenetan ohiko izan da etxearen deskribapena edo kokapena agertzea eta horrelakoak izan ziren ohikoak Bizkaian, horien lekuko dira gure deiturak, etxe izenetatik sortuak. Baina XVI. mendetik aurrera etxeak ugaritzearekin batera sistema zaharra ez zen nahikoa eta hemen ere, lehenago Nafarroan bezala* -ena *osagaiaz osatutako etxe izenak ageri ziren. Osagai honen jatorrian noren kasua dugu eta 'etxea' adiera du, Kasu honetan Garaiko* Barrainkua *deitura dugu oinarrian eta horrenbestez* Barrainkuaren etxea *esangura du.*

# Bekoetxea (-a) etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Bekétxe



43° 10' 6"    2° 35' 40"    *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Eraikin hau *Arriagagoxinaga* (**Ikus Arriaga-goxinaga**) baserriaren lurretan eginda dago. Kokapenari erreparatuta hartu zuen izena, eta auzotarren artean *Bekétxe* moduan ezagutzen da.

Bizitza bakarreko etxea XX. mende erdialdeko modari jarraituz egina. Solairu bat eta ganbara ditu, bi isurialdeko teilatuaren azpian. Bere fatxada oso sinplea da. Erdian sarrerako atea dauka, 1983an egindako babesteko teilatutxoarekin, eta leihoa alde bakoitzean. Inposta marra batek banatzen ditu bi solairuak. Ganbarakoan, izena eta data dituen errotulua dago eta, honekin lerrokatuta, bi leiho puntu erdiko arkudunak. Aldamenetan, hiruna txori-toki. Hormak pintatuta dauzka, kolore biziekin, eta zuria utzi zuten kantalak, inposta marra eta bao guztien inguruetako molduretarako. Inskripzioak dio: *"BEKO-ETXE / AÑO-1953"*.

toponimia

*Aparteko azalpenik behar ez duen izena. Hala ere Bizkaian eta bereziki Durangaldeko usadioan ohikoa da horrelako izenen aurrean auzo izena jartzea Zengotitabengoa izenean bezala, nahiz eta kasu honetan eman ez.*



# Belákortuzarra etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Belákortu / Belákortusárra

*"... una caseria llamada Belacortuzarra, en jurisdicción de la anteiglesia de Berriz... en la barriada de Eitua, ocupa una planta solar de setenta y tercio estados y consta de dos viviendas, piso bajo, alto y camarote..."*
*DJE 6/43 or. (1891)*



*43° 9' 59"* *2° 35' 27"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Bizitza bakarreko baserri honen gaineko lehen aipamen dokumentala Bizkaiko su-erroldetan aurkitzen dugu, eta 1704. urtean *Lacortu* moduan agertzen den arren, *Belakortu* baserriari erreferentzia egiten dio. Ondorengo dokumentuetan, *Belacortua* (1796, Bizkaiko su-erroldak) eta *Belacortu* (1865, DJE, 1/ 107. or.) aipuak agertzen dira. 1859ko izendegian *Belacórtus* aurkitzen dugu, ete horrekin erreferentzia egiten zaio zonalde honetan aurkitzen ditugun baserri biei: *Belakortu* eta *Belakortubarria* (**Ikus Belakortubarria**). Hor bereizi izan dira beti *Belkartuzarra* eta *Belakortubarria*; *Belacurtu viejo* (1905, BUA, 40), *Belacortu-zarra* (1910, BUA, RU) eta *Belacurtu nuebo* (1905, BUA, 40). *Belákortu* eta *Belákortusárra* dira berriztarrak erabilitako ahozko formak.

2007tik aurrera berriztatutako baserria, bi isurialdeko teilatua eta hiru solairu dituena. Behekoa harrizkoa da, harlangaitza hormetarako utzi zuten eta harlandua, arku, leiho eta kantaletarako. Hormigoirik ez da falta leihoburuetan eta inposta marran ere. Lehenengo solairua zuriz pintatuta dauka eta ganbarakorako adreilua erabili zuten. Fatxada oso zabala du eta leihoak dira nagusi, erdiko atarteko arkuaren arabera antolatuta. Hala, bina leiho ditu honen aldamenetan; errepikatzen direnak lehenengo solairuan, balkoiaren ezker-eskuman. Eta gorengo pisuan, frontisean, hiru leiho eta beste horrenbeste txori-toki bikote.

toponimia

Belakortu *izeneko etxe bi daude Berrizen zaharra, jatorrizkoa dena eta berrria. Dokumentazioan eta ahoz* Belakortuzarra *eta* Belakortubarria *esaten bazaie ere sarritan Belakortu huts hutsean erabiltzen da berriena izendatzeko. Badirudi izenaren osagaiak* bele *txori izenetik sortutako* Belako *pertsona izena eta artu. (* **Ikus Belakortu***)* .

# Belakortu etxebizitza

Aldaerak: Belakortubarria
Ahozkoa: Bélakortu barrídxe



43° 9' 58" 2° 35' 27" Berriz Iruditan / J.A. Ramos

*"... una casa molino llamada de Belacortu o sea la principal de Belacortubarri en jurisdicción de Berriz, que mide ciento dos estados... se compone de piso llano con dos muelas de maiz y una de trigo, piso principal con dos viviendas y camarote..." DJE 6/47 or. (1891)*

*Zalduerrekaren* ur-emariak aprobetxatuz, *Anbotobitxi* azpian martxan jarritako errota honen gaineko lehen aipuak XIX. mendean aurkitzen ditugu: *Belacortu nuebo* (1857, BUA, Viv.) ageri da, aurretik eraikitako *Belakortuzarra* baserritik bereizteko (**Ikus Belakortuzarra**). Dokumentazioan aldaketa gutxi jasan ditu, izenari erreparatuta betiere, "*nuebo*" osagaiarekin lagunduta agertzea baita aldaketa bakarra.

Errota izandako baserria da, nahiz eta begiratu batean ez duen produkziorako eraikinen itxurarik. Baina etxea soilik izan balitz, ez zuen izango beheko solairu itsua, arku ederraren alboetan faltan botatzen diren leihoak barik, *Goikoerrotan* (**Ikus Goikoerrota**) gertatu antzera, honetan

## toponimia

Belakortu *izeneko etxe bi daude Berrizen zaharra, jatorrizkoa dena eta berrria. Dokumentazioan eta ahoz* Belakortuzarra *eta* Belakortubarria *esaten bazaie ere sarritan* Belakortu *huts hutsean erabiltzen da berriena izendatzeko. Badirudi izenaren osagaiak* bele *txori izenetik sortutako* Belako *pertsona izena eta* artu*. Bigarren osagai hau ilunagoa da. Mendebaldean nahiko arruntak dira pertsona izen eta artu osagaiaz osatutako baserri eta bereziki dorre izenak:* Martiartu *(Erandio),* Markoartu *(Okondo),* Gastiartu *(Okondo),* Untzaluartu *(Igorre). Inoiz igartu-rekin lotu izan da, eta egia da Gordexolan badela antzekoa den* Sanchoyerto *eta Zamudion* Galbarriartu*, baina gure irudiko gaia ilunagoa da eta jabetzarekin lotu behar dela uste dugu, agian hartu aditzarekin. Gordexolako izena bitxia da euskal eremuan ageri delako. XVIII. mendean* Sanchuyertu *eta* Sanchuyerto *moduetan ageri da.*






*BUA / Mapa topografikoa, 1933*

alde batean falta baita. Lehenengo solairua da bereziena eta honetan indarra dute arku gaineko hiru baoek, leihoak eta erdiko balkoiak. Solairu berean daude beste bi leiho, izkinetan; eta ganbaran, beste bi, lehenengo solairukoekin lerrokatuta. Bi isurialdeko teilatua dauka, oso hegal zabalekoa eta horri eusteko, ohikoa den legez, egurrezko besoak erabili zituzten. Etxearen hormak harlangai-tzaz jaso zituzten eta harlandua erabili zuten, kantaletan, bao guztien ertzetan eta arkuan. Honen giltzarrian daukagu idatzita egin zeneko data: 1807.

# Berrizbeitia (-a) etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa:



43° 10' 8" 2° 34' 34" Berriz Iruditan / J.A. Ramos

*"... la casa principal llamada Berrizveitia, sus casas accesorias y pertenecidos radicantes en la Cofradía de Eitua barrio del Sur de la Anteiglesia de Berriz... la casa principal... consta de dos viviendas: la de la izquierda contiene con su piso llano zaguan, cocina, un dormitorio y cuadras; en el piso principal dos dormitorios y pajar y encima camarote. La otra habitación se compone de zaguan, cocina y cuadras en el piso llano, tres dormitorios y pajar; en el piso principal, y encima camarote. Ocupa su planta solar tresciento sesenta metros y noventa y tres decímetros cuadrados..."*
*DJE 3/178 or. (1877)*

*Zalduerreka* ibarrera begira aurkitzen dugun baserri honi buruzko lehen aipuak XVII. mendekoak dira, hots, *Berrizbeitia* (1669 BAHP, A1263/32), nahiz eta jakin baserria 1572. urtean egindakoa dela. Bestela, ez du aldaketa nabarmenik ezagutu izen honek ordutik ona, dokumentazio guztian izen bera aurkitzen baitugu, grafian izandako aldaketa txikiak izan ezik, adibidez: batzuetan banatuta agertzen da, hau da, *Verriz Veytia* (1745, Bizkaiko su-erroldak), eta, beste batzuetan, *V-z* idatzia *B-z* idatzi beharrean. XIX. mende bukaeratik aurrera, forma jarraitua eta B-z idatzitakoak nagusitzen dira, hau da, *Berrizbetia* (1910, BUA, RU). Berriztarren artean, oso ezaguna den baserri honen ahozko forma *Berrísbéitti* dugu.

Baserri etxe ederra, bikaina, oso koloretsua, erabilitako material desberdinak direla medio. Leihoburu bateko datak besterik pentsarazi dezakeen arren, XVII. mendean hedatutako etxe mota da, oso antzekoa den *Isuntza (***Ikus Isuntza***)* frogatu daitekeen moduan. Hiru

toponimia

*Berriz izena jatorriz ez zen lur eremu zabal bat, udalerria gaur egun, baserri edo gune txiki bat baizik. Hori da beste udal askoren kasu bera, Getxo, Munitibar, Zornotza etab. Berriz izenak zer esan nahi duen, berriz, ez dakigu. Euskal Herrian ohikoak dira -iz amaiera duten elku izenak, ekialdean, Nafarroan, -itz. Amaiera honek jabetza adiera du eta aurrean pertsona izena izaten da. Ondorioz pentsatu behar dugu izen honen aurrean jaun baten izen dugula. Berrizbeitia etxe izenean behekoa dela esaten zaigu.*





*Berriz Irudita*n

gorputzez osatua, beheko solairuko erdian atarte zabala du, molduraz atondutako egurrezko dintel baten babesean, eta aldamenetan, harrizko gorputzak. Bigarren solairua eta ganbara egurrezko egituraz egin ziren, tarteko adreiluzko hormekin. Bitxia da ikustea adreilu grapatuak erabili zituztela haritzezko egurrak estaltzeko. Azken urteotan berriztatze sakon bat egin diote eta fatxada zerbait aldatu dute. Hala, beheko partea berdin samar utzi dute, baina goikoetan leihoak lekuz aldatu edo zabaldu egin dituzte, eta ganbarako balkoi irtena, aldenik alde zeukana, kendu egin dute, barnekoa egiteko, frontiseko egurren egitura aprobetxatuz. Txori-tokiekin ere antzera jokatu dute. Bukatzeko, beheko solairuari begiratuko diogu eta bertan dagoen inskripzioaren inguruan ere pare bat berba esatea tokatzen da. Beheko pisuko harrizko bi gorputzak zeharo desberdinak dira. Bata oso harlandu onaz egina bada, hormak eta leihoen moldurak barne; bestean kalitate oneko harria kantaletarako eta leihoa taiutzeko utzi zuten, hormetan harlangaitza usatu baitzuten. Argi dago bi momentu desberdinetan burututako eraikuntza izan zela, zaharragoa aprobetxatuta egindakoa. Eta hau egitea agindu zuten jabeek, kartela manierista batean idatzita, inskripzio bat utzi zuten leihoburuan: Gurutzearen eta Jesusen izenaren anagramaren albo banatan, *"ESTA - OBRAIZIERON - AZER / BARTOLOMEDEBERIZ / EMARIA - SU - MUGER - 1572".*





# Berrizbeitialdekoa (-a) etxebizitza

Aldaerak: Katalanena
Ahozkoa: Berrísbéitti



*"... la casa accesoria de Berrizveitia en tres cuerpos unidos... en dicho barrio del Sur consta de una vivienda, conteniendo en el piso llano cocina y tres cuadras, en el piso principall sala, un cuarto y pajares: en el piso segundo otra sala y cuarto y encima de estos camarote, y a su nivel en uno de los cuerpos camarote. Ocupa su planta solar doscientos setenta y siete metros y sesenta y nueve decímetros..."*
*DJE 3/178 or. (1877)*

*43° 10' 7"* *2° 34' 36"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*Berrizbeitia* (**Ikus Berrizbeitia**) baserriaren ondoko eranskina edo arnaga dugu honako hau. Eraikin honen gaineko aipuak XIX. mendekoak dira, eta lehen erreferentzia 1825ean egindako polizia-erroldakoak da, bertan *Arnaga de Berrizveitia* agertzen zaigularik. XX. mendean, aldiz, Berrizko Udalak egindako erroldetan (1910 eta 1967) *Berrizbeitia accesoria* moduan jasotzen da. Antza, aldeko eraikin honetan baserriaren errenteroak bizi ziren. Berriztarren artean, eraikin biak *Berrísbéitti* moduan ezagutu badira ere, azken hori *Katalan* moduan ere ezagutzen da. Jatorrizko *Berrizbeitia* baserria bereizteko, ostera, "*andikua*" eransten diote.

Oin irregularreko baserria da, hiru isurialdeko teilatupean. Fatxada nagusiari begiratu ezkero, oso ondo antzeman daitezke 1877ko dokumentuak aipatzen dituen hiru aldeak. Fatxada hori ez dago ohikoa izaten den lekuan eta teilatuaren gailurraren paralelo egin zuten. Ezkerraldekoa da etxeari dagokiona. Baoen antolamendua garbia da. Izan ere, beheko solairuan, atea eta leihoa ditu, biak harlanduzko ertz ederrekin; goikoan, lerrotu gabeko bi leiho; eta gainean, balkoi irtena, zementuzko zorua eta burdin sarea duena. Beste bi gorputzetan dauden leihoak aldi desberdinetan zabaldu zirela esan daiteke, ordena jakin barik ageri dira, batzuk harlanduzko ertzekin, beste batzuetan forro erara erabili zuten harria, eta erdikoetan ertzok pintatu egin zituzten. Ostean ere badu ate ederra, dobelazko dintelduna, dokumentuan aitatzen den kortakoa izango zena. XIX. mendeko eraikina da ezbairik gabe, luzituta egon zena bere garaian, orain harlangaitza bistaratu badiote ere.

toponimia

*Berrizbeitia etxearen ondoan eraikitako etxea.*



# Bitzabalondo

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Bitsábalondo



*43° 10' 1"* *2° 35' 39"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

N634 errepidearen ondoan eta *Altzategi* (**Ikus Altzategi**) parean eraikitako etxea. Bizitza bakarreko eraikina da. Zein urtetan zehazki egin zen ez dakiela baina ziur aski XX. mende hasierako eraikina dela aitortu digu jabeak. 1967an Berrizko Udalak egindako eraikin-erroldan *Bitzabalondo* moduan izendatzen da etxe hau. Auzotarren artean *Bitsábalondo* da ahozko forma erabilia.

XX. mendeko lehenengo erdialdeko etxea da. Soila da, baina arrazionalismoaren eragina ere igartzen zaio lehen solairuko begiratokian eta balkoi kurbatuan. Harlangaitza erabili zuten etxea jasotzeko eta junturak zuritu egin zizkioten. Hormigoizkoak dira, berriz, baoen dintelak, begiratokia eta balkoiak. Bi isurkiko teilatua dauka, eta gailurra ardatz duela atondu zen fatxada nagusia. Atea eta bi alboetako leihoak ditugu beheko solairuan; horiekin lerrokatuta, begiratokia eta leihoak daude, eta frontoian, aldiz, balkoia.

toponimia

*XX. mendearen hasieran eraikitako etxea, Bitzabal neologismo sabindarra da, "carretera" adierazten duena.*

# Donarioena (-a) etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Donáridxona



43° 9' 54" 2° 34' 33" Berriz Iruditan / J.A. Ramos

*"... la casería rústica titulada de Donariena... radicante en la Cofradía de Eitua jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende con su plazueleta o zaguan una superficie de cuarenta y tres estados, y la que se compone de una habitación con cuadra, su alto y camarote..." DJE 1/74 or. (1864)*

Bizitza bakarreko baserri honen gaineko lehendabiziko erreferentzia 1745eko Bizkaiko su-erroldetan aurkitzen dugu, hots, *Donario*. XIX. mendetik aurrera, *Donarioéna* (1859, BUA, Nmcr.) aldaera nagusitzen da, eta hortik aurrera eta gaur egun arte, horrela ezagutzen da baserria, hau da, *Donariona* (1967, BUA, CE). Auzotarren artean eta ahozko transmisioaren ondorioz, *Donáridxona* moduan ezagutzen da.

Duela oso gutxi berriztaturiko baserria da. Jatorrian etxe estua zen, eta atea alde batean zeukan, leiho bi lehenengo pisuan eta ganbaran, berriz, txori-tokiak. Beranduago, beste gorputz bat erantsi zioten eskumaldean. Azkeneko obretan, neurri batean behintzat, jatorrizko itxura mantendu dute, eta bi gorputz zirenak bateratu egin dituzte, bien artean zegoen harrizko horma ezkutatu egin baitute, luzituta eta pintatuta. Harrizko dintel ederra daukan atea erdian geratu da. Goiko pisuko leihoak maila berean daude, eta frontoian, lehengo txori-tokien ordez, leiho txiki bi zabaldu dituzte, harriz forratutako horman. XIX. mendeko etxea zena antzeman daiteke oraindik.

## toponimia

Donario *eta "etxe" adiera duen* -ena *atzizkiaz sortutako baserri izena. Aipatutako ena atzizkiak 'etxe' adiera badu ere jatorriz NOREN kasutik atera zen:* Donarioren etxea > Donariona*.* Donario *hitz arrunta da, "dohaina" edo "bertute" eta "saria" adiera dituena. Kasu honetan pentsatzekoa da jabearen edo bertan bizi izan zenaren ezizena dela eta ondorioz* Donarioren *etxea adierazi nahi du.*



# Done Petri Txiki

ermita

Aldaerak: San Pedro Txiki
Ahozkoa:



43°10'21"  2°35'57"  Berriz Iruditan / A. Arbulu

Done Petri, benetako izenaz Simon, apostoluetako bat izan zen eta Erromako lehenengo apezpikua. Katolikoentzat Elizaren buru izendatu zuen Jesusek eta lehenengo aitasantua izan zen. Horretaz gain Zeruko giltzak eman zizkion eta horregatik irudietan giltzak eskuan ageri da. Erroman hil zuten gurutzean 67. urtean, baina hiltzailei buruz behera jartzea eskatu zien, uste baitzuen ez zela nor Jesus bezala hiltzeko. Bere hilobiaren gainean eraiki zen Vatikanoko Done Petri katedrala.

Tradizioaren arabera Neron kristauen kontra hasi zenean Petrik Erromatik alde egitea erabaki zuen. Apia portalea igaroa bezain laster Jesusekin egin zuen topo eta galdetu zion: «Quo Vadis, Domine?» Nora zoaz Jauna?) eta Jesusek erantzun zion: «Romam vado iterum crucifigi» («Erromara berriro gurutzean hiltzera»).

Petri lotsatuta Erromara itzuli zen eta 3 urte beranduago martirizatu zuten.

Trentoko kontzilioak ekarri zuen santuen euskarazko izenak baztertzea eta erdarazkoak nagusitzea. Horregatik Bizkaian ohikoa izan da jatorrizko *Petri* izenaren ordez euskaraz ere gaztelaniazko *Pedro* erabiltzea. Horretaz gain euskaraz badira era asko santu hau deitzeko, arruntena *Peru* da, gure artean pertsona moduan oso erabilia eta Sabino Aranak asmatu zuen *Kepa*. Izen hau arameozko *Kephas*-etik atera zuen Jesusek arameoz esan baitzion Simoni eliza eraikiko zuen haitza (arameoz *kephas*). Geroago hitz hori latinez Petrus moduan itzuli zen eta handik sortu ziren *Pedro*, *Peter*, *Petri*, *Pierre*...

Berrizko zaindariaren ermita da, Isuntza -edo Ereñan- dagoen arren. Tramu bakarreko eraikina da, luzenka. Elizpea oinaldean dauka bakarrik, sarrera gisa. Honetan, zokalo eta egurrezko zutikoekin batera, alde bateko horma azpimarratu behar da, iparreko haizeetatik babesteko. Barrualdea ikusgai dago, oinaldean hormaren ordez, zokaloaren gainean egurrezko hesia dagoelako, eta honetan, atea. Sakristia eta kanpai-horma ere badu, azken hau hormigoizkoa izanik.



# Eizkoa (-a) etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Íxkoa / Íxkua / Brábona



43° 10' 11" 2° 35' 13" Berriz Iruditan / J.A. Ramos

*"... la casería titulada Eizcoa y sus pertenecidos, radicante en termino jurisdiccional de Berriz... se compone de... una planta solar de mil novecientos ince pies cuadrados... y se compone en su piso llano de zaguan, cocina, aposento, cuadra, tejabana y horno; y en el piso principal de tres cuartos, desvan y en el resto hasta el tejado pajar. Su construcción es de paredes de mampostería por los cuatro costados, las armaduras interiores de cal y canto y tabiques, los suelos entablados..."*
*DJE 3/172 or. (1877)*

Bizitza bateko baserri honen inguruan aurkitzen dugun lehen erreferentzia 1704koa da Bizkaiko su-erroldetan, hots, *Eyzcoa*. Hortik aurrera, mendeetan zehar izenak aldaketa gutxi ezagutu ditu: *Eízcoa* (1859, BUA, Nmcr.), *Eiscuaga* (1905, BUA, 40. or.) eta *Izcoaga* (1967, BUA, CE.). Auzotarren artean, *Íxkoa* edo *Íxkua* moduan ezagutzen da, baita *Brábona* moduan ere, Javier Bravo zenaren abizenaz, alegia.

XVII. mendean egiten zirenen trazan burututako baserri-etxea da. Fatxadan antzematen den antolamenduari begiratuz gero, esango genuke Berriz aldean aurkitu ohi dugun estiloari jarraitzen diola, nahiz eta guztiz itxuraldatu duten esku-hartze bat baino gehiago igarri.

Egin zenean, baliteke guztiz bete ez izana hasierako asmoa, eta hiru gorputzez osatuta egongo zen ziur aski. Harrizkoak izango ziren seguruenik aldameneko biak (harlangaitzezkoak zehazki, kantal batzuk ezik), eta erdian atarte zabala izango zuen, bi zutoinek eta erdiko zutikoak eutsitako egurrezko dintelaren babesean. Gaineko solairuak egurrezko egituraz jaso ziren, tarteko adreiluzko hormekin. Bertan, ditu leihoak eta ganbaran, leihoak eta txori-tokiak. Beranduagoko berrikuntzetan, atartea ixteko hormak egin, leihoak zabaldu eta eskumako harrizko gorputza izango zena teilape bihurtu zen, baita ezkerraldeko eranskina ere. Bi isurkiko teilatua du.

toponimia

*Haitz hitzaren eratorrietako bat da Eiz. A. Irigoienen ustez Bizkaian badira haitz hitzaren erabilera erakusten duten toponimoa zaharrak eta bat dugu Urdaibaiko Axpe, 1051an Izpea moduan ageri dena.*

# Ereñaga

etxebizitza

Aldaerak: Ereña
Ahozkoa: Éreña



43° 10' 15" 2° 35' 57" *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*"... la casa llamada Ereñaga... situada en jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende dos areas y cuarenta y siete centiareas de cabida, y la que se compone de sus correspondientes pisos, cuadras, divisiones y habitaciones..."*
*DJE 3/43 or. (1871)*

Egun *Ereñaga* baserria desagertuta dago, jatorrizkoaren lekuan gasolindegia baitago. Baserria eta bertan zegoen taberna ezagunak izan dira oso Berrizen, eta XVI. mendetik hona, hainbatean dokumentatuta agertu dira. Alde horretatik, aldaketa gutxi izan duen leku-izena da, eta dokumentazioan beri grafia berdinarekin aurkitzen dugu: *Ereñaga* (1669, BAHP, A1263/32), *Ereñaga* (1825, PE/1825) eta XX. mende hasieran *Ereñaga* (1910, BUA, RU). Berriztarren artean, beti *Éreña* moduan ezagutu izan da, eta izen hori hartu du egun eraikin berrian dagoen jatetxea. Eraikin berria XX. mende amaieran egin zen, jatorrizko baserriaren harriak erabiliz.

Etxe berria da, errepidetik urrunduta eraiki dutena 1996an, jatorrizko lekuan barik. Tradizioari eusten dio eta baserri zaharraren arkua aprobetxatu zuten berriaren atartea egiteko eta, honen arabera, fatxada nagusia atontzeko, Barroko garaian egiten zen estiloan. Bi solairu eta ganbara ditu, bi isuritako teilatuaren babesean. Eta indarra ardatzak du. Hau da, arkuaren gainean balkoia dauka, bi leiho luzeak batuz, eta gorengo, beiratea. Alboetan, leiho bana aldeko eta solairuko.

toponimia

*Ereño landarea xumea bada ere gure toponimian ugaria izan da. Zuhaitz hau, Laurus nobilis oso preziatua izan zen antzinatetik eta irabazleei bere ostoz egindako koroa ematen zitzaien.*



# Ereñagaurrekoa (-a) etxebizitza

Aldaerak: Erramuntxona / Goixargi
Ahozkoa: Ereñáurre / Errémontxóna / Goidxárgi

*"... la casería titulada Ereñaga-aurrecoa en el termino de la Anteiglesia de Berriz, compuesta de una sola vivienda, ocupa una superficie de ciento veinte y cinco metros, cincuenta y tres centímetros, con inclusión del antusano y franquicias..." DJE 4/148 or. (1879)*



*43° 10' 15"* *2° 35' 46"* *Berriz Irudítan / T. Angoitia*

*Ereñaga* baserriaren (**Ikus Ereñaga**) aurrean eraikitako baserri honen gaineko lehen aipu dokumentalak XIX. mendekoak dira: 1825. urteko polizia-erroldan *Ereñaga aurrecoa* agertzen da. Hortik aurrera, forma bera agertzen da dokumentu guztietan. Egunerokotasunean, berriz, aldaera desberdinak izan ditu azken urteotan: aipatutako *Ereñáurre* izenetik hasita, jabearen izenean oinarritutako *Errémontxóna* izenetik pasatuz, eta nondik datorren ez dakigun izen batera helduta, hau da, *Goidxárgi*. Egungo jabeek ez zekiten nondik zetozen izen horiek, eta orain urte batzuk, erosi zutenetik, *Erramuntxona* izenez izendatu dute.

Baserri honetan material zaharrak berrerabili dira eta aspaldiko tradizioa berreskuratzeko ahalegina egin dutela dirudi. Hori antzeman daiteke, bereziki, kantaletako tantai ederrei eta alboetako egurrezko egiturari erreparatu ezkero. Pisuen banaketa, ostera, ohikoa da. Behekoan, erdian, atartea dauka, zurezko dintelduna eta leiho bana, bi aldeetan. Gainean, hauekin lerrokatuta, balkoia erdian, eta leihoak aldamenetan. Eta ganbaran, leihoa eta txori-toki bana. Aitaturiko egurrezko elementuez gain, material bera erabili dute leihoburu guztiak eta balkoiaren karela egiteko. Harlangaitzezkoa da beheko pisuko horma eta gainekoa luzituta eta pintatua dauka.

toponimia

*Ereño landarea xumea bada ere gure toponimian ugaria izan da. Zuhaitz hau,* Laurus nobilis *oso preziatua izan zen antzinatetik eta irabazleei bere ostoz egindako koroa ematen zitzaien. Kasu honetan izenaren bigarren osagaiak jatorrizko* Ereñaga *baserriaren aurrealdean egindako etxea bereizteko jarri zen.*

# Errotazarra (-a) etxebizitza

Aldaerak: Biritxinaga
Ahozkoa: Erròtasar



43° 10' 46" 2° 35' 56" Berriz Iruditan / J.A. Ramos

*"... la casería rústica titulada Errotazarra... situada en la barriada de Eitua jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende con su horno ochenta y nueve estados cuadrados superficiales de planta solar, la que es de una vivienda, y se compone de piso bajo y alto, con sus correspondientes pisos, cuadras, divisiones y habitaciones..."*
*DJE 2/67 or. (1866)*

Egun guztiz berritutako bizitza biko baserri honen gaineko lehen aipu dokumentala Bizkaiko su-erroldetan aurkitzen dugu *Errotazarra* (1796). Hortik aurrera, jasan dituen aldaketa bakarrak *Rotazarra* (1866, DJE, 2/ 33. or.) eta *Errotazar* (1967, BUA, CE) izan dira. Ahozko transmisioan, *Erròtasar* aurkitzen dugu. *Biritxinaga* moduan ezagutzen da baserria, familiaren abizenaren ondorioz.

Errota izan zena, XVIII. mendean, hurrengo gizaldian baserri bihurtu zuten eta oraintsu guztiz aldatu eta berriztatu dute, gaur egungo etxeen premietara egokituz. Hasierako bi bolumenak kontserbatzen ditu, aldatsean egin baitzuten, baina baserri tradizionalen antzik kasik ez dute, batez ere lehenengo egin zenak, ez materialetan, ezta fatxaden antolamenduan ere. Berriagoan, aldiz, alboko fatxada batean hurbildu ziren modelo ezagunagoetara, harria erabili zutelako beheko solairuan eta adreilua, frontoian. Besteetan balkoien presentzia eta baoen desberdintasuna da nabarmena.

toponimia

*Izen arrunta ulertzeko aparteko azalpenik behar ez duena.* Errota *hitza latinetik hartu zuen euskarak. Latinez* rota *zen eta gaztelaniak ere hartu zuen eta* rueda *bihurtu eta eraikuntza baino biraka dagoen harria zen. Antzina Bizkaian errota esateko* bolu *erabiltzen zen eta horregatik sarritan ageri da toponimian* Bolibar, *esaterako* Errotaibar *da, baina aspaldian desagertu zen hitz hori eguneroko euskaratik eta toponimoetan baino ez da gorde.*



# Hormastegi

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Ormástei

*"... la casa nueva llamada Ormastegui... que comprende cuarenta y seis pies de frente, y de fondo cincuenta, y ocupa con inclusión de su huerta contigua, cuatrocientos cincuenta estados equivalentes a diez y siete áreas y doce centiáreas, y la que se compone de sus correspondientes pisos, divisiones y habitaciones..."*
*DJE 2/118 or. (1867)*



*43° 10' 37"* *2° 34' 56"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Berez *Legorreta* (**Ikus Legorreta**) baserriaren eranskina zena, gerora etxebizitza izatera pasatu zen. Horrela, eraikin honen gaineko lehen aipuak XIX. mendekoak dira. Udal-izendegian, 1859. urtean *Hormástegui* izenarekin aurkitzen dugu etxea. Hortik aurrera, aldaketa gutxi izan zituen, eta horietan nabarmenena H galtzea izan da. Horrela, XIX. mendearen bigarren erdian *Ormastegui* (1867, DJE, 2/ 118. or.) izenez ikusiko dugu. XX. mendean Gipuzkoako herriaren grafiari jarraituz, behin baino gehiagotan *Ormaiztegui* (1910, BUA, RU) eta *Ormastegui* (1967, BUA, CE) jasotzen da. Ahozko erabileran, *Ormástei* formarik izango da ohikoena.

XIX. mendeko etxea da. Zabalkuntza batzuk izan ditu, fatxadetan ondo baino hobeto ikusten direnak eta hasieran izango zuen itxura zeharo aldatu diotenak. Fatxada nagusia oso modu orekatuan antolatua dago, baina jatorrizko etxea izango zena gaur egun eskuma aldean dagoena da eta garai batean etxe dotorea izango zen. Beranduago gehitu zitzaion ezkerraldeko gorputza eta azkeneko pisuko txapitula eta terrazak. Aurreko antolamendua oso tipikoa zen, hiru ardatzetan antolatzen baitzen, erdikoa nabarmenduaz. Horrela, atea eta bi leiho zeuzkan beheko solairuan, eta balkoiak gainean, horiekin lerrokatuta eta denak dinteldunak, erdikoa irtena izanik. Hiruretan, karel gisa, diseinu bereko burdinsarea erabili zuten. Azpimarratzekoa da etxearen baoen neurria, denboraren joanaren seinale. Gaur egun, harlangaitza desestali dute; baina, egin zenean, hormak luzituta eta pintatuta egongo ziren, nabarmenagoak eginaz ertz guztietako harlanduak. Balkoi nagusiak inskripzio hau dauka leihoburuan: *"HORMASTEGY ERYGYDA / POR M. JOSEFA DE AGUIRRE / AÑO 1864"*.

toponimia

*1859an ageri da dokumentazioan etxe hau eta ondorioz garai horretan eraiki dela pentsatu behar dugu. Litekeena da* Hormastegi *izen hori jatorriz deitura edo ezizena izatea Bergaran XIX. mendean badelako* Ormastegi *deitura jatorriz Gipuzkoako* Ormaiztegi *herrikoa bide dena.*





# Isuntza

etxebizitza

Aldaerak: Isuntzagoikoa / Isuntzaemetikoa
Ahozkoa: Ixúntza / Ixúntze / Ixúntze Goikóa / Ixúntze Goikúe



*43° 10'28"* *2° 35'43"* *Berriz Iruditan / T. Angoitia*

Eusko Jaurlaritzak monumentu historiko izendatutako baserri honen jatorria XVI. mendean kokatu behar dugu. 1669. urtean, *Ysunza* (1669, BAHP, A1263/32. or.) moduan erregistratuta aurkitzen dugu, eta izen berarekin aurkituko dugu XVIII. mende hasierako suerroldan, hots, *Ysunza* (1704); 1796an, aldiz, *Ysunza de Suso* aurkitzen dugu, goialdean kokatuta dagoen baserria adierazi bezala ('suso' hitzak goiko adiera du). Ildo beretik, 1866an *Yzunzagoicoa* (DJE, 2/ 41. or.) aurkitzen dugu. XX. mendean aldiz, *Yzunce Emeticua* (1905, BUA, 40. or.) eta *Izunza emeticoa* (1967, BUA, CE) aldaerak ezagutu dira. Lehenengoan goikoari erreferentzia egiten dio, eta besteak, ostera, *Isuntzabekoa* (**Ikus Isuntzabekoa**) etxeari. Berriztarren artean, *Ixúntza*, *Ixúntze*, *Ixúntze Goikóa* eta *Ixúntze Goikúe* ahozko erak erabili izan dira.

Baserri etxe ederra, *Berrizbeitia* (**Ikus Berrizbeitia**) baserriaren arkitekturarekin lotura zuzena duena. Askotan aipatu dugun egitura du. Hiru gorputzez osatua, beheko solairuko erdian

toponimia

*Mendebaldeko toponimian oso arrunta da isun- hitza, Abadiñon, gertu, Isundegi etxea dugu eta Tribiñun eta Gordexolan* Isuntza. Isun *hitzak bi adiera ditu, arrunta den "multa" eta Nafarroan "itxitako lur eremua". Dena dela adiera hori ez dator bat isun osagaia duten leku askorekin eta hori dela eta beste aukera izan daiteke* osin *hitzaren aldaera izatea. Bigarren osagaia ugaritasuna adierazten duen* -tza *atzizkia da.*





*Isuntza / Berriz Irudiitan*

atarte zabala duena, egurrezko dintel baten babesean, eta aldamenetan, harrizko gorputzekin. Ohikoa den moduan, leiho bana dauka hauetan, harlandu ederrez inguratuta, eta eskumakoak hegia ere molduratua du, leihoburuko inskripzioarekin batera. Atartearen zabalera dela eta, euskarri moduan ordena toskanarreko koloma erabili zuten. Bigarren solairua eta ganbara egurrezko egituraz egin ziren, tarteko adreiluzko hormekin, eta hauetan leihoak eta txori-tokiak zabaldu zituzten. Segurutik, aldenik aldeko balkoia izan zuen ganbaran, baina gaur egun desagertuta dago. Fatxada nagusiari erreparatu ezkero, berehala konturatuko gara eskuma aldeko beheko gorputza zabalagoa dela eta beherago, sotorako atea dauka, harrizko dintelduna. Bitxia da ikustea adreilu grapatuak erabili zituztela haritzezko egurrak estaltzeko. Bi isurialdeko teilatua dauka, miru buztana deritzona gehituta, eta bere hegal zabalari eusteko egurrezko besoak erabili zituzten. Amaitzeko, inskripzioak dioena, tondo baten barruko giltza bien alde banatan: *"IHS MR (tondoa) A 1678"*, hau da, Jesus eta Mariaren anagramekin batera, data.

# Isuntzabekoa (-a) etxebizitza

Aldaerak: Isuntza / Bekoa / Isuntzandikoa
Ahozkoa: Ixúntze Bekóa / Ixúntze Bekúe



43° 10'22" 2° 35'51" Berriz Iruditan / J.A. Ramos

*"... la casería de Ynzunza-andicoa o de yuso... en la barriada o cofradía de Eitua en jurisdicción de Berriz, ocupa cuatrocientos diez y siete metros cuadrados de planta solar y el edificio de enfrente sesenta y tres metros y ochenta y cuatro decímetros. La vivienda principal de dicha casa, ó del lado Oriente, consta de zaguan comun, ante cuadra, cocina y dormitorios y cuadras en el piso llano; encima otros dos dormitorios, camarote y pajar. La otra vivienda del lado Oeste consta de cuadra en el piso llano y de cocina y tres dormitorios en el piso alto, con sobrado o camarote encima de estas piezas; y con el edificio accesorio indicado que consta de cuadra abajo y pajar arriba..."*
*DJE 7/113 or. (1903)*

Bizitza biko baserria da honako hau, eta lehendabiziko aipu dokumentala Bizkaiko su-erroldetan aurkitzen dugu 1704. urtean: *Ysunza de Yuso*. Gerora, *Ysuzagaaurre* (1826, BAHP, A372/15.) moduan agertzen da, eta baita *Ynzunza andicoa* (1903, DJE, 7/ 113. or.) moduan ere. XX. mendean forma horrekin agertzen da dokumentazioan. 1859ko izendegian *Yzunzas* (1859, BUA, Nmcr.) aurki daiteke, zonalde berean dauden *Isuntza* **(Ikus Isuntza**) eta *Isuntzadeskarga* (**Ikus Isuntzadeskarga**) baserriei erreferentzia eginez.

Auzotarren artean erabilitako ahozko formetan, *Ixúntze Bekóa* eta *Ixúntze Bekúe* dira nagusi. Jasotako informazioaren arabera, jendartean *Isuntza* izenez ezagutzen dira bi etxeak, goikoa (*Isuntza* baserria) eta behekoa. Baserri hau eta *Isuntzadeskarga*) jabe berarenak ziren, eta, dirudienez, hark egin zuen *Sanpedro txiki* ermita (**Ikus Done Petri Txiki**).

Inskripzio batek adierazi mo-

toponimia

*Isuntza* baserri multzoko beheko aldean dagoen etxea. XVIII. mendean bazegoen etxe hau, baina itzulita ageri da izena "Ysunza de Yuso" eta ondorioz ezin dugu jakin lehenago be(he)koa deitzen zuten edo *beitia* edo *beaskoa*, inguruan arrunta den bezala. Etxeak ez duenez deiturarik eman pentsatu behar dugu XVII. mendean edo beranduago sortu zela.






*BUA / Mapa topografikoa, 1933*

duan, XVIII. mendean jasotako baserria da, 1723an, nahiz eta aurreko mendean eratutako tipologiakoa izan. Honetan, txikiagoa den arren, gertu dagoen *Isuntzarekin* zor handia du, baita *Berrizbeitiarekin* ere. Fatxada nagusiaren ezkerraldean jasotako eranskinak orijinala itxuraldatzen badu ere, ondo antzeman daitezke ohiko hiru gorputzak, harrizkoak alboetakoak eta erdikoa, atarte zabal baten gainean, egurraz eta adreiluzko hormekin armatua. Alboetako gorputzetan harlandua erabili zuten kantal guztietan eta leiho ertzetan, eta harlangaitza, hormetan. Hasieran hauek luzitu eta pintatuta egongo ziren, lehengo solairuan ikusten den legez, baina gaur egun behekoan bistara atera dute. Erdian daukan atartea oso zabala da eta egurrezko dintelari eusteko, koloma toskanarra erantsi zioten, hormigoiaz konponduta ageri dena. Gainean, zurezko eta adreiluzko egituran irekitako bi leihoak ikus ditzakegu, lehenengo solairuan, eta txori-tokiak, ganbaran. Egurra adreilu grapatuekin ezkutatuta dauka.



# Isuntzadeskarga

etxebizitza

Aldaerak: A
Ahozkoa: Deskárga



*43° 10' 18"* *2° 35' 49"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*"... la casa o casería llamada Ynzunza Descarga... en la indicada cofradía o Barriada de Eitua, situada a los cien metros próximamente al Sur de la casa de Ynzunza-andicoa, es de una vivienda, distribuida en su piso llano, en zaguan cocina, dormitorio y cuadra; en el piso alto una sala y dos dormitorios, con camarote y pajar; ocupa esta casa doscientos treinta y cuatro metros cuadrados de planta solar, y la pequeña tejabana horno de su frente veinte y un metros cuadrados..."*
*DJE 7/113 or. (1903)*

Ereñaga inguruan aurkitzen diren *Isuntza* etxeetatik apalena da honako hau, eta XVIII. mendetik dokumentatuta daukagu. Bizkaiko su-erroldetan *Descarga* izenez aurkitzen dugu 1745ean, eta forma hori mantendu du XX. mende hasierara arte, dokumentu bitan *Ynzunza Descarga* (1903, DJE, 7/ 113. or.) eta *Yzunza descarga* (1910, BUA, RU) agertzen zaizkigularik. Hortik aurrera, izenaren bigarren zatia bakarrik erabiltzen da baserria aipatzeko *Descarga* (1939, BUA, 37. or.). Auzotarren artean, eta oro har berriztarren artean, *Deskárga* forma erabil-tzen dute ahozko transmisioan.

Baserri etxe trinkoa, leiho txiki eta gutxikoa. Salbuespenak dira lehenengo pisukoa, handiagoa dena, eta behekoa, beranduago zabaldu zutena. Harri zaharragoak mantentzen baditu ere oinarrian, harlangaitzaz jaso zuten, harlandua soil-solik utzi zutelako leiho, kantalak eta sarrerako arkua egiteko, guztiz zentratu barik dagoena, XIX. mendean sarritan egiten zen legez, ganbara aldea zabalik uztea moduan. Teilatua bi isurkitakoa da. Ateko janba batean irakur daitekeen dataren arabera, 1829an berreraiki zuten.

toponimia

Isuntza-*rako aipatu izan den moduan (***Ikus Isuntza***), izenaren jatorria izan daiteke* osin *hitzaren aldaera izatea. Bigarren osagaia ugaritasuna adierazten duen* -tza *atzizkia da. Izenaren bigarren zatia aldatsetan gurdiak eta mandoak zamatzeko lekuek hartzen zuten deskarga izena, gaztelaniatik zuzen-zuzenean Antzuola eta Zumarraga arteko mendate ezagunean bezala.*



# Matzaga

etxebizitza

Aldaerak: Matzagaerdikoa
Ahozkoa: Mátza



43°10'4" 2°34'39" Berriz Iruditan / T. Angoitia

*"... una casería titulada Mazaga... en la cofradía de Eytua de la Anteiglesia de Berriz, es de una habitación compuesta de portalada, cocina, dos cuartos y cuadras en el piso bajo, y en el superior, de sala, cuatro cuartos, camarotes y pajares, tiene además un horno con tejabana y al frente una arnaga o accesoria... contiene de planta solar con inclusión del zaguan... ciento cuarenta y cuatro estados equivalentes a cinco areas y cuarenta y ocho centiareas..." DJE 5/125 or. (1884)*

Bizitza bakarreko baserri honen gaineko lehen aipamena Bizkaiko su-erroldetan aurkitzen dugu: *Masaga* (1704). Gerora, aldaketa gutxi aurkitzen dugu baserri honi erreferentzia egiterako orduan. Horrela, 1859an *Mázagas* agertzen da urte horretako udal-izendegian, inguru horretan aurkitzen ditugu hiru baserriei erreferentzia eginez: *Matzagagoikoa* (**Ikus Matzagagoikoa**), *Matzaga* eta *Matzabekoa* (**Ikus Matzagabekoa**). Hiru baserri horietatik honako hau erdian kokatzen da, hortik 1905ean *Mazaga Erdicua* (1905, BUA, 40. or.) moduan agertzea. Auzotarren artean, ahozko transmisioan *Mátza* nagusitu da.

Baserri-etxe ederra dugu, neurri handikoa. 1829an obra handi bat jasan zuen, lehenengo solairuko bi leihoen artean dagoen datak argi uzten duen moduan. Hala ere, teilatuaren gailurrarekiko simetria eza deigarria da, eta horren arrazoia izan daiteke XIX. mendeko lanekin gertatuko zen aldaketa nabarmena, etxea handitu zutenean. Aipatzeko moduko beste

toponimia

*1704ean etxe hau* Masaga *moduan ageri da eta 1825era arte ez da* Mazaga *ageri. Horren ondorioz pentsatu behar dugu jatorrizko izena ez dela Matzaga, Matsaga baizik. Hau horrela balitz pentsa genezake osagaiak* mahats *landare izena eta lekua edo ugaritasuna adierazten duen* -aga *atzizkia direla.*





*Berriz Iruditan / T. Angoitia*

ezaugarri batzuk ere baditu. Esaterako, ezkerraldeko gorputzeko baoak maila baxuagoan daude, eta lehenengo solairuko hormak egurrezko eta adreiluzko armadurarekin jasoak zituzten, egurra adreilu grapatuekin tapatuta badute ere, *Isuntza*, *Isuntzabekoa* eta *Berrizbeitia* etxeetan legez. Sarrera gisa atarte zabala dauka, arku eskartzano baten bidez egiten dena. Gainean, bi leiho ditu, ganbarako txikitxoaren azpian, ardatza izan daitekeena markatuz. Egurrez eta adreiluez gain, hormetan erabilitako harria ohikoa da, hots, harlangaitza, eta harlandua baliatu zuten, aldiz, kantaletan eta bao-inguru guztietan. Lehenengo solairuan, honako hau dioen inskripzioak bat dago bi orri zintzilik dituen gurutze baten alde bietan: *"ANO DE / 1829"*.



# Matzagabekoa (-a) etxebizitza

Aldaerak: Matzagazpikoa
Ahozkoa: Mátza Bekúe



*"... la casa nueva accesoria nombrada Mazaga-azpicoa... consta de dos viviendas, compuesta de dos cocinas con sus cuadras y portaleza en el piso bajo, y e el alto o superior... tres cuartos, camarote y pajares... contiene con inclusión de sus zaguanes y horno ciento ochenta y dos estados, o sean siete areas y noventa y dos centiareas..." DJE 5/125 or. (1884)*

*43° 10' 3"* *2° 34' 47"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Baserri honen gaineko lehen aipu dokumentala Bizkaiko su-erroldetan aurkitzen dugu: *Mazaga de Yuso* (1796). 1825eko polizia-erroldan *Masagavecoa* agertzen da, eta lehen aipatu dugun moduan, 1859ko udal-izendegian *Mázagas* agertzen da, inguruan aurkitzen ditugun hiru baserriei erreferentzia eginez: *Matzagagoikoa* (**Ikus Matzagagoikoa**), *Matzaga* (**Ikus Matzaga**) eta *Matzabekoa*. Hiru baserri horietatik honako hau beheko aldean kokatzen da, eta hortik datozkio *Mazaga-azpicoa* (1863, DJE, 1/35. or.) eta *Mazagabecoa* (1967, BUA, CE) erreferentziak. Auzotarren artean, ahozko transmisioan *Mátza Bekúe* nagusitu da.

XIX. mende hasierako baserria, handia, bizitza bikoa, fatxadan ere nabarmena den ezaugarri. Simetrikoki pentsatutako fatxada dauka, nahiz eta beheko solairuko eskumaldean leiho bat itxi zuten, ondoan handiagoa zabaltzeko. Salbuespen horrekin, dena antolatuta dago ardatzaren arabera. Erdian, atarte zabala du, arku karpanel baten babesean. Eta honen bi aldeetan, aipatutako leihoak. Gaineko bi solairuetan, alde bakoitzak hiru ditu, lehenengoan, eta bi, bigarrenean. Ganbarakoa itsua da eta zurezko imitazioko egitura egin dute frontoian. Hormetako harlangaitza, jatorrian, luzituta eta pintatua egongo zen; eta bistan, kantaletako, arkuaren eta leiho guztien ertzetako harlanduak egongo ziren, frontoian ikus daitekeen legez.

toponimia

*Matzaga etxe multzoko beheko aldean dagoen etxe honek izen bi eduki ditu denboran zehar egun erabiltzen dena, 1825etik dokumentatua eta XIX. mendean noizean behin ageri den* **Matzaga(a)zpikoa.**



# Matzaganekoa (-a) etxebizitza

Aldaerak: Matzagagoikoa / Matzagagoiena
Ahozkoa: Mátzagoikúe

*"... la casería rústica titulada Mazaga-ganecoa...situada en la barriada o Cofradía de Eitua de la Anteiglesia de Berriz, que comprende con inclusión del antusano o basurero, horno contiguo y un retazo de huerta ciento noventa y ocho estados,... la que es de una vivienda, y consta de piso bajo a manera de entresuelo, con cuadras y de habitación superior con cuadras y pajares..."*
*DJE 3/85 or. (1873)*



*43° 10' 9"* *2° 34' 35"* *Berriz Irudítan / T. Angoitia*

*Berrizbeitia* (**Ikus Berrizbeitia**) baserriaren atzealdean kokatuta dugun *Matzaga* inguruko baserri honen gaineko lehen aipuak XVIII. mendekoak dira, eta zehazki, Bizkaiko su-erroldetan agertzen da: *Masaga de Suso* (1704). Hortik abiatuta, XIX. eta XX. mendeetan zehar *-ganekoa* edota *-goyena* amaierarekin osatuta ageri zaigu baserri-izen hau: *Masagaganecoa* (1815, BAHP, A275/34. or.) eta *Mazagagoyena* (1867, DJE, 2/54. or.). Udalak egindako 1967ko erroldan ere, *Mazaganecoa* topatzen dugu. Ahozkotasunean herritarrek *Mátzagoikúe* era erabiltzen dute.

Jatorrizko taxuketa XVII. mendean hedatu zena du, nahiz eta beranduago esku-hartzeren bat izan duen. Horrela pentsarazten digute teilatuaren gailurrak duen posizioak eta hegoaldeko fatxadan egurrezko egitura eta adreilua erabiltzeak ere. Beheko solairuan ohiko hiru gorputzak antzematen dira, aldamenetakoak harrizkoak izanik, eta erdian, atartea dauka, egurrezko dintelaren azpian. Solairu horretako harlanduen kalitatea bistakoa da, kantal denetan eta alde bakoitzaren erdian dauden bi leihoetan ikus dezakeguna. Aitzitik, lehenengo pisua material eskasagoaz jaso zuten, eta hiru baoak ere egurrezko dintela dute, egurrezkoa delarik ere bai ganbarako balkoi luzea. Azken solairu horretan, adreilua erabili zuten horma egiteko.

toponimia

*Lehen aipatu dugunarekin jarraituz, pentsa genezake osagaiak* mahats *landare izena eta lekua edo ugaritasuna adierazten duen* -aga *atzizkia direla. Izenaren bigarren zatia goiko aldean kokaturiko baserria dela errefentzia egiteko erabilia izango zen.*

# Olabarria (-a) etxebizitza

Aldaerak: Olábarri
Ahozkoa: Olábarri



43° 10' 37" 2° 36' 1" Berriz Iruditan / J.A. Ramos

*Arrierreka* ubidearen alboan eraikitako baserri honen gaineko aipuak nabariak dira XVIII. mende hasieratik aurrera. Bizkaiko lehen su-erroldaz geroztik (1704), hurrengo mendeetan Berriz elizateko dokumentazioan izena ia aldaketarik gabe ageri zaigu, ola honen gaineko aipamenetan: *Olabarria* (1704, Bizkaiko su-errolda), *Olavarria* (1825, PE/1825), *Olabarria* (1874, DJE, 3/ 106. or.) eta *Olabarri*, Udalak egindako azken erroldan jasotzen den moduan. Ahozkotasunean ere, azken modu hori erabiltzen da, *Olábarri*, hain zuzen ere.

Ez da baserri-etxe handi horietakoa; baina oso interesgarria da halere, XVI. mendeko etxe

*"... la Ferreira llamada Olavaria... radicante en jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz que comprende con inclusión de la habitación, tejabana contigua a la Ferrería que sirve para carbonera, los terrenos antusanos, antepara y demas accesorio que se hallan en un coto hasta dar con el ponton de hacia la caseria de Olalde y el estolde doscientos ochenta y seis estados equivalentes a mil ochenta y siete metros..."*
*DJE, 3/ 106 or. (1880)*

*"... la casería titulada Olavarria en el termino de la anteiglesia de Berriz, en el barrio de Eitua,... consta de una vivienda que se compone en el piso llano de cuadra, en el priso principal de cocina, dos cuartos y sala, y sobre los cuartos el camarote y pajar, ocupa una planta solar de cuarenta y tres y tres cuartos de estados..."*
*DJE, 4/ 195 or. (1880)*

toponimia

*Azken mendeotan* ola *hitza erabili izan da erreka ondoan burdina sortzeko edo lantzeko egoten ziren eraikuntza bereziei, burdinola izenaz ere ezagutuak, baina adiera zabalagoa izan du hitz honek denboran zehar. Garai batean ola edo kortabaso herri basoetan egiten ziren belardi biribilei esaten zitzaien. Baina esanahi arruntena hasieran aipatutakoa da. Kasu honetan* barria *egoteak* zaharra *bazela adierazten digu.*





*Berriz Irudi̇tan / T. Angoitia*

dotore baten aztarnak eta egitura gordetzen dituelako, burdinolaren administraziorako erabili baitzen. Sasoi hartan egiten zen moduan, oso harlandu onaz jaso zuten, baina etxe trinkoa eta iluna zen, leiho gutxi eta txikiekin atonduta. Dena dela, nabarmentzekoa da alboko fatxada bateko leihoa, oso dotorea eta landua, Berpizkundeko modari jarraituz. Tenore berekoak dira fatxada nagusiko alde batean dagoen puntu erdiko arkudun atea eta haren gaineko armarria, materialen kalitatearen seinale, eta harrizko eskailerak ere bai, sotoa eta atea komunikatzen dutenak. Goiko solairuak, ostera, egurrezko egitura dauka, eta adreiluzko hormekin burutu zuten. Horretan ere leihoak txikiak dira, eta goragoko pisuan txori-tokiak ditu. Teilatuaren hegal zabalari eusteko, egurrezko habeak jarri zituzten.




# Olabarrietxebarria (-a) etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa:



43° 10' 33" 2° 36' 2" Berriz Iruditan / J.A. Ramos

*"... la casería rústica titulada Olabarrico Echevarria... situada en la barriada de Eitua de la Anteiglesia de Berriz, que comprende con inclusión de su antusano cuarenta y tres estados, o sean ciento sesenta y tres metros cuadrados superficiales de planta solar, y la que se compone de piso llano con zaguan cocina aposento y cuadras, de piso principal con sala, tres cuartos y pajar, siendo su construcción de paredes de mampostería por las cuatro fachadas..."*
*DJE 2/20 or. (1886)*

Abadiñorekin mugan dagoen baserri honen gaineko lehen aipamena 1859ko udal-izendegian aurkitzen dugu. Bertan, *Olabarrías* aipatzen da, eta horrek esan nahi du *Olavaria* (**Ikus Olabarria**) eta *Olabarrietxebarria* dagoeneko existitzen zirela. 1905ean *Olabarri nueba* (BUA, 40. or.) agertzen da, eta handik gutxira, *Olavarrico Echevarria* (1910, BUA, RU.). Udalak eginiko azken erroldan, *Olabarriechevarri* (1967, BUA, CE) moduan jaso zen.

XIX. mendearen erdialdeko baserri etxe tipikoa dugu; egiturak goranzko tendentzia dauka, zabalean hedatu beharrean. Bi isurkiko teilatuaren azpian, hiru ardatzetan eta hiru solairutan antolatutako fatxada dauka, erdikoa izanik nabarmenena. Horrela, atearen gainean leiho luzea egin zioten, eta ganbaran, balkoia zabaldu. Azkeneko berrikuntzan hormigoizko zorua jarri zioten. Aldamenetako ardatzetan, leihoak handitu zituzten; ganbarakoak, berriz, txikiagoak dira, teilatuaren formari egokitzeko. Harlangaitzaz eraikitako baserria da, baina oso kalitate oneko harlandua erabili zuten kantal guztietan eta bao denen ertzetan. Jatorrian, hormak luzituta eta zurituta zituen, baina 90eko hamarkadako berrikuntzan harlangaitza desestali zuten.

toponimia

*Azken mendeotan* ola *hitza erabili izan da erreka ondoan burdina sortzeko edo lantzeko egoten ziren eraikuntza bereziei, burdinola izenaz ere ezagutuak, baina adiera zabalagoa izan du hitz honek denboran zehar. Garai batean ola edo kortabaso herri basoetan egiten ziren belardi biribilei esaten zitzaien. Baina esanahi arruntena hasieran aipatutakoa da. Kasu honetan* barria *egoteak* zaharra *bazela adierazten digu.*

# Olakueta Auzunea



*Berriz Iruditan*

Lau etxe, horrela jasotzen da *Antzinako Berriz. Bizimodua eta ohiturak* liburuan Berrizko tren geltoki ondoan XX. mende hasieran aurkitzen ziren etxeak. Goiko argazkian ikusi ahal ditugu etxe horiek, *San Antonio* ermitaren ondoan multzokatzen direnak. Errepidearen ondoan gelditzen diren etxeak honako hauek dira: eskumatik hasita *Txaparrona* moduan ezagutzen den eraikina dugu, egun oraindik dagoen eraikina da honako hau eta bertan tradizio luzeko denda aurkitzen dugu.

Segidan San Anton eta *San Antonio* Paduakoari dedikatutako ermita dugu. Biak oso santu preziatuak ziren, bata, animalia eta soloen zaintzailea zelako, eta besteari ere antzekoetan errezatzen zitzaion, baita uzta ona eskatzeko, eta pobre, goseak edo haurdun zeudenen laguna zelako. Eraikina oro har XIX. mendean egin zuten moduan mantentzen da. Tramu bakarrekoa eta absideduna da, baina elementurik esanguratsuena sarrerako irtendako gorputza da, errepidera begira. Fatxada guztiz harlanduzkoa da eta bertako puntu erdiko arkuaren marko gisa funtzionatzen du. Erremate moduan, kanpai-horma barrokoa dauka. Dokumentuetako aipuak XVII mendekoak, behintzat, badira, baina gaur egungo eraikina XIX mende erdialdekoa da, arkuaren gaineko plakako inskripzioak horrela dioelako: *"LOS DEVOTOS / DE SAN ANTONIOS AÑO / DE 1845"*.






*Moldaketa: A. Arbulu*

1. *Txaparrona*
2. *San Antonio*
3. *Sanantonioetxebarria*
4. *Renobalesena*
5. *Pantaleonena*
6. *Eskolak*
7. *Fonda*
8. *Estebanena*
9. *Forjie*
10. *Urzabal*
11. *Urzabalberrizbeitia*
12. *Agirretxe*
13. *Pedro Juanena*
14. *Perratzaillena*
15. *Bodegie*
16. *Píona*
17. *Limonada fabrika*
18. *Ilipona*
19. *Estaziñue*
20. *Bizikleta fabrika*
21. *Sanantonioaurre*




## Txaparrona


Berriz Iruditan / J.A. Ramos

Hurrengoa *Sanantonioetxebarria* dugu, ermitaren ondoan kokatzen den eraikina honen inguruan XX. mende hasieran aurkitzen ditugu lehen aipamenak: *San Antonio Echebarria* (1905, BUA, 40. or.). 1967ko Udal-erroldan ere, izen bera aurkitzen dugu, hots, *San Antonio echevarri* (BUA, CE). Berriztarren artean, izenarengatik baino, bertan dagoen tabernaren izenagatik ezagutzen dute, Bodégillie, hain zuzen ere.

XX. mendearen lehen erdialdean egin ziren estiloko etxe baten aurrean gaude, egun etxebizitzatan banatutakoa. Sarrera alde batean dauka, eta fatxada nagusia kalera ematen duena da. Oso era sinplean ditu antolatuta baoak: balkoia erdian, eta leiho bana aldamenetan; beheko pisuan izan ezik, leihoak baino ez daudelako. Ganbaran, berriz, bi leiho daude. Atzeko fatxada ere antzera burutu zuten, egun aldatuta ageri bada ere. Azkeneko berriztatze-lanen ondoren, itxura zeharo aldatu da, eta jatorrizkoa bakarrik teilatupean ikus daiteke, horma luzituak eta baoen inguruko moldura zapalak kontserbatu dituelako. Uneko tendentziari jarraituz, harria desestali zioten, eta baoen inguruan dauden moldurak mantendu dituzte soilik.

## San Antonio


Berriz Iruditan / J.A. Ramos

Jarraian 1930. hamarkadan eraikitako etxea dugu, *Perrátzailliena* moduan ezagutu dena. 1967ko udal zentsoan *Herrador* (BUA, CE) moduan agertzen da. Egun herritarrek Batzokia moduan ezagutzen dute, bertan baitago Berrizko EAJren egoitza.

Eraikinari dagokionez, perratzailearen etxea zena dugu oraingoan, beheko solairuan zuena bere lanlekua, atea alde batean zeukana eta leiho handi samarrez argituta. Etxerako sarrera, berriz, ostean dago, atxikitako eskailerak igota. Lehenengo solairu honetan leihoak modu erregularrean zabaltzen dira eta fatxada nagusian miradorea (fabrikakoa) eta balkoia bereizten dira. Gainean, ganbaran, frontoian erremataturiko leiho bi. Hormen tratamendua ere desberdina da solairuen arabera. Esaterako, behekoan kantaleak harriz babestu ziren eta hormak, kolore ilunez margotu. Inposta marra batek bereizten du lehenengo solairutik. Honetan kolore zuria erabili zen. Eta teilatupekoan, adreilua. Teilatua bi isuritakoa da, miru buztanarena deritzona gehituta. Eraikina Euskal Herrian XX mendeko 30eko hamarkadan nagusitu zen euskal estilo modernoan dago egina.

toponimia

*Euskal toponimian oso arrunta da santuen izenak etxe izenetan agertzea. Baselizek sarritan, etxe bat izaten zuten ondoan seroren bizileku. Geroago, eraikin berriagoetan, ohikoa zen santu izena jartzea eta ez hainbeste, bertako toponimo zaharra agertzea. Kasu honetan etxe berria da.*



# Perratzaillena



Berriz Irudian / J.A. Ramos

# Pedro Juan




Berriz Irudian / J.A. Ramos

Hurrengoa *Pedro Juanena* dugu. Etxe honi, antza, berritze handiena 1922. urtean egin zitzaion. Dena den dokumentazioan ez dugu honen berri izan, eta baliteke XX. mende hasieran dokumentatutako *Echevarria de Olacueta* (1905, BUA, 40) izatea. Auzotarren artean bertan dagoen tabernaren izenaz ezagutzen da, *Pedro Juanena*.

Dirudienez, eraikuntzak berrikuntza bat baino gehiago jasan ditu, eta azkena, taberna bihurtzeko egindako lanak ditugu, guneko hirigintzara ere moldatu zutelarik. Hala ere, fatxada bateko inskripzioak adierazi legez, XX. mende hasieran datatu beharko genituzke fatxadetan gailentzen diren horma luzituak eta zurituak eta harlanduz inguratutako bao ederrak, elkarren gainean ondo lerrokatuta daudelarik, bi isurkiko teilatuaren babesean. Bertan ikus daitekeen inskripzioak dio: *"REEDIFICADA POR / PEDRO JUAN GASTELU-URRUTIA / Y CORNELIA BARRUETA / 1922"*.

toponimia

*Euskara* Pedro *eta* Juan *esateko era asko izan dugu. Arruntenak* Peru *eta* Joan *"Yoan" izan badira ere beste asko ere izan ditugu. Erromako lehenengo apezpikua izendatzeko Peri, Petri, Betiri ageri dira Euskal Herri osoan eta, esaterako Arrigorriagako Abrisketako San Pedro elizaren aurrean dagoen etxea* Doneperiaga (Done *Peri, alegia) da. Baina euskararen bazterkeriaren ondorioz euskal era jatorrak galdu ziren eta* erdarazko Pedro *eta* Juan *hasi ginen erabiltzen. Kolonizazio honi aurre egiteko asmoz Sabino Aranak izendegi bat egin zuen 1897an. Tamalez euskarazko izen jatorrak sartu beharrean, Petri eta Joan(es) kasu honetan izen gehienak asmatu zituen,* Kepa *eta* Jon *kasurako.*

# Sanantonioetxebarria



*Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Dokumentazioan agertzen denari jarraiki, *San Antonio* ermitaren parean kokatzen zen baserri bat zen. 1796an, Bizkaiko su-erroldan *San Antonio Aurre* jasotzen da, eta izen berarekin mantentzen da hortik aurrera, hau da, *San Antonio aurre* (1825, PE/1825), salbuespen batzuk izan ezik, hala nola *San Antonio aurre Olabe de los Molinos* (1866, DJE, 1/ 206. or). XX. mendean ere, *San Antonio Aurre* (1905, BUA, 40) moduan agertzen da. Berriztarren artean *Kintiñena* moduan ezagutzen da.

> *"... la casería rústica titulada de San Antonio aurre Olabe de los Molinos... situada en la barriada de Eitua jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende con su zaguan, plazuela y huerta cuatrocientos ochenta y seis estados cuadrados superficiales de area y la que es de dos viviendas, componiéndose cada vivienda de piso bajo y alto a manera de entresuelo, con sus correspondientes cuadras y habitaciones..."*
> *DJE 1/206 or. (1866)*

*Sanantonioaurre* baserriaren ezkerretara beste hiru eraikin aurkituko ditugu jarraian: *Urzabal, Urzabalberrizbeitia* eta *Agirretxe.*

*Zalduerreka* (**Ikus Zalduerreka**) ondoan eraikitako etxea da. *Olakueta* inguruan eraikitako lehen etxeen artean kokatzen da, eta XIX. mende amaieran agertzen dira lehen aipamenak: *Urzabal* (1877, DJE, 3/ 178. or.). XX. mendean ere, izen horrekin dokumentatzen da, hots, *Ursabal* (1910, BUA, RU), nahiz eta berriztarren artean *Abárketeruana* moduan ezagutzen den.

XIX. mende amaierako etxea dugu. Beranduago, hainbat obra egin dizkiote, gaur egun duen itxura hartu arte. Orduko egituratik goranzko tendentzia eta fatxada nagusia hiru ardatzen arabera ordenatzeko joera gordetzen ditu, Geroago, atea albo batera eraman zuten, jatorrizko leihoa desitxuratuz, eta pisu bat gehiago jaso. Halaber, alboko fatxadetan leihoak zabaldu ziren, egurrezko dintelarekin, baita begiratokia ere. Kalitate oneko harria erabili zuten, bereziki baoetan.



# Urzabal



Berriz Irudiitan / J.A. Ramos

*"... una casa denominada Urzabal con su huerta contigua... sita en termino jurisdiccional de Berriz... consta de una vivienda que se compone de piso llano, entresuelo, piso alto y camarote, ocupando una planta solar de veinte y cinco estados que juntamente con otras ochenta y dos que ocupa la huerta que le corresponde contigua a la misma casa, forma una medida total de la finca de doscientos siete estados..."*
*DJE 4/ 57 or. (1878)*

Gerora, horren ondoan egindako eraikinak *Urzabalberrizbeitia* izena hartuko du. Antza, garai batean korta izan omen zen. Dokumentazioari erreparatuta, aipamen gutxi aurkitzen ditugu, eta denak XX. mendekoak dira: *Uzabal de Berrizveitia* (1905, BUA, 40. or.) eta *Urzabalberrizbeitia nueva* (1967, BUA, CE). Auzotarren artean, etxe hau ere *Ursábal* moduan ezagutzen dute.

# Urzabalberrizbeitia



Berriz Irudiitan / J.A. Ramos

Eraberritze sakona jaso duen pisu biko etxea da. XX. mende hasieran, gaur egungo premietara egokitzeko aldaketak egin zizkioten. Antzinako itxura berreskuratzeko asmoz, harria desestali dute, eta leihoen egurrezko dintelak indartu. Balkoiaren euskarri den begiratokia egiteko, adreiluaz eta egurrezko egituraz baliatu dira. Horrez gain, jatorrizko balkoi baten harrizko mentsulak integratu dituzte, egurrezko habeekin batera, begiratokiari eusteko. Isurki biko teilatua dauka.

Errepide ondoan aurkitzen diren hiru etxe horietatik azkena dugu hau, Bilbo-Baiona autopistako zubipean kokatzen dena. Herrigunean egonda, erreferentzia gutxi ditugu eta erroldan zenbakiz ageri da adierazita. Herritarren artean, *Agirretxe* moduan ezagutzen da, ate gainean izen hori jarrita duela.

toponimia

*Toponimo arrunta etxe-izen bihurtu zena. Izenaren osagaiak arruntak dira ur, kasu honetan ibai edo errekaren sinonimoa eta zabal, kasu honetan hedadura esangurarekin. Beraz,* "errekazabal" *edo* "ibaizabal" *da.*

*Urzabal sarreran aipatu dugun moduan, toponimo arrunta etxe-izen bihurtu zena.* "errekazabal" *edo* "ibaizabal" *esanahia du izenaren lehen osagaiak eta bigarren osagaia lotuta dago gertu dagoen* Berrizbeitia *(***Ikus Berrizbeitia***) baserriarekin.*

# Agirretxe



*Berriz Irudiitan / J.A. Ramos*

XX. mende erdialdeko etxea, bere garaian tailer gainean egiten ziren horietakoa. Egitura oso sinplea da, solairu bakarra baitauka, eta teilatupeko ganbara, bi leihotxori esker antzeman daitekeena. Etxearen soiltasuna sarrerak hausten du. Izan ere, kanpoaldeko eskaileren jomuga alboan atxikitako gorputza da, teilatu independentearekin. Baoak leihoak dira, eta fatxadetan, behealdean harlangaitza erabili bazuten ere, etxeari dagokionean, luzituta ageri da.

*Txaparronatik* gora beste bi eraikin ageri dira. Lehena *Renóbalesena* moduan ezagutzen zena eta hurrengoa *Pantáleonena*, ere ezagututa *Maríamórronena*, eraikin honek miradore ederra zuen, *San Antonio* ostera ematen zuena.

Hortik aurrera Elizondora bidean aurkitzen ditugu Olakuetako *eskolak* plazan, *Fonda* eta *Estebanena*, azken honen parean, bidearen beste aldean *Forjie*.

*Frontoitik* abiatuta ezkerretarantz *Limonada fabrika* aurkitzen dugu, *The Sodawatter* moduan ezagututa. Segidan Berriz-Olakuetako *estáziñúe*, eta *Bizikleta fabrika*. Etxe multzoaren artean beste hiru eraikin gelditzen dira, *Ilipona*, Pedro Juan tabernaren atzean gelditzen den etxea, eta *Perratzaillenaren* atzean gelditzen diren *Bodegie*, *Pedro Juanena,* eta *Píona*, *mataderue* zegoen tokian.

toponimia

Agirre + etxe *izen osagaiaz osatuta dugu izen hau. "*Agirre *familiaren etxea" esan nahi duena. Dena den,* Agirre *baino* Agirresakona *familiakoa da. Abizen luzea izanda, erabaki zuten abizenaren lehendabiziko zatia baino ez hartzea. Horrela ezagutzen zen bertan zegoen denda bat ere.* Deitura+etxe *egiturako etxe izenak modan jarri ziren XX. mendean Mendebaldeko tradizioan* -ena *erabiltzen baitzen,* Agirrena *izango zen kasu honetan.*

*Pantaleon izena arrunta izan zen garai batean gaur egun Aitor edo Eneko bezala. Aipatutako santua medikua zen eta III. mendean martirizatu zuten. Bere odola gordeta dago Italiako Rabello hirian eta urtean behin urtu egiten da, martiri aurreko egunean. Italiako inguru hori Espainakoa zen garaian odol pittin bat ekarri zuten Madrilgo Real Monasterio de la Encarnaciónera eta hor ere errepikatzen da mirari hau. Buruko mina eta tuberkulosia zutenek jotzen zuten honegana.*

# Olaldea (-a) etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Olálde



43° 10' 41" 2° 35' 57" *Berriz Irudittan / J.A. Ramos*

*"... una casa titulada Olalde... sita en la cofradía de Eitua de la anteiglesia de Berriz... consta de piso llano y piso alto, el piso llano esta distribuido en zaguan de entrada, cocina, tres dormitorios y el resto destinado a cuadras teniendo además un horno de pan cocer por el lado Sur unido a la casa; el piso alto en dos departamentos destinados el uno a camarote y el otro pajar. Ocupa su planta doscientos sesenta y siete metros cuadrados ó sean setenta estados y diez y ocho céntimas..." DJE, 5/ 218. or. (1887)*

*Olabarria* (**Ikus Olabarria**) baserriaren goialdean kokaturiko baserri honen inguruan ere aipuak ugariak dira XVIII. mendetik hona. Kasu honetan ere, aldaketarik jasan ez dituen izen baten aurrean gaude, eta mendeotan forma bera mantendu izan da dokumentazioan: *Olaldea* (1704, Bizkaiko su-erroldetan), *Olaldea* (1857, BUA, Viv) eta *Olalde* (1967, BUA, CE). Ahozkotasunean ere, modu bera erabiltzen da, *Olálde*, hain zuzen ere.

Baserri ederra dugu, 1800 inguruan egiten zirenen tankerakoa, bere atarteko arku zabalak frogatu legez. Bi isurkiko teilatuaren azpiko fatxada nagusia oso era simetrikoan burututa dago, erdialdea indartuz. Hala, arku bikainaren gainean balkoia dauka, hormigoizko zoruduna, eta albo bakoitzean, bina leiho eta ganbaran beste bat, gailurraren azpian. Beheko solairuan, berriz, leiho bana du arkuaren alde bakoitzean, biak hormigoizko plaka batez hornituak, goikoak bezala. Hala ere, nabarmendu behar da jatorrizko harlanduzko leihoa itsututa dagoela. Etxea harlangaitzezko hormekin jaso zuten, harlanduzko kantalekin indartuta, arkua eta leihoa moduan. Hormak garai batean luzituta eta pintatuta egongo ziren, goiko pisuetan ikus daitekeen moduan; baina beheko solairuan, berritu zutenean, harria desestali egin zioten.

toponimia

*Lehenago esan bezala garai batean ola edo* kortabaso *herri basoetan egiten ziren belardi biribilei esaten bazitzaien ere, azken mendeotan* olak *burdina sortzeko edo lantzeko egoten ziren eraikuntza bereziak izan dira. Kasu honetan* -alde *posposizioaz ageri da lagunduta. Izenak ez du aldaketarik izan denboran zehar amaierako artikuluaren galera izan ezik antzina* Olaldea *baitzen.*





# Olazarra (-a) etxebizitza

Aldaerak: Maizterrena / Saltua
Ahozkoa: Olásar / Sáltue / Sentrala / Máistexena



*43° 10' 46"* *2° 35' 59"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Burdinola eta errota izandako eraikina da hau, *Arrierreka* ubidearen urak aprobetxatzen zituena, eta 1745ean agertzen da Bizkaiko su-erroldetan lehenbizikoz: *Olazarra*. XIX. mendean euskarazko aipamenak gaztelaniazkoekin uztartzen dira; horrela, 1825eko polizia-erroldan *Molino de Olazarra* aurkitzen dugun bitartean, urte batzuk geroago Berrizko Udalak egindako izendegian *Olázarco-errotéa* (1859) moduan jasotzen da. XX. mendean, *Olazar* (1939, BUA, 37 / 1967, BUA, CE.) eta *Olazarra* (1945, BUA, 37. or.) formak nagusitzen dira. Dena den, eraikin honek beste izen batzuk ezagutu ditu, batez ere auzotarrek erabiltzen dituztenak. Ahozko erabilpenean, izan ere, *Olásar*, *Sáltue*, *Sentrala* eta *Máistexena* formak erabiltzen dira.

*"... la Ferreria titulada Olazarra en el termino de la anteiglesia de Berriz, ocupa con sus anteparas de piedra setecientos treinta y ocho metros cuadrados de planta solar, y el antusano con las franquicias de tres de sus lados setecientos noventa y cinco metros..."*
*DJE, 4/ 215 or. (1880)*

*"... la casa molino de Olazarra en el termino de la anteiglesia de Berriz en la barriada de San Pedro, que consta en su piso llano de zaguan, cocina, aposento, sala de molino con tres ruedas para harina de maiz, horno y cuadra; y en el piso alto un cuarto dormitorio mediano sin mas localidades; ademas a los lados de la casa su cortijo y una tejavana, los cuales, la casa con su horno ocupan en junto una superficie de doscientas veinte y cuatro metros..."*
*DJE, 4/ 222 or. (1880)*

## toponimia

*Aurrekoan esan bezala garai batean* ola *edo* kortabaso *herri basoetan egiten ziren belardi biribilei esaten bazitzaien ere, azken mendeotan* olak *burdina sortzeko edo lantzeko egoten ziren eraikuntza bereziak izan dira. Kasu honetan zaharra dela esaten zaigu. Aipu zaharrenetan Olazarra moduan dokumentatu dugu, baina azken -a hori artikulua da eta gaur egun ahoz ez da jadanik erabiltzen. 1858an* Olázarco-errotéa *ageri da eta 1905ean horren itzulpena den* Molino de Olazarra*. Adibideetan ikusten den bezala garai horretan ongi erabiltzen zen artikulua eta horregatik erdaratzean* Olazarra *osorik ageri da.*





*Olazarra, 1959, Guregipuzkoa.net/"Ola-zar. Caserío (Berriz)" © CC BY-SS: Ojanguren, Indalecio.*

Izenak dioen moduan, burdinola izandakoa da, baina baita errota ere. Ekoizpenean erabilitako eraikinaren antza gordetzen du oraindik ere, nahiz eta berriztatze sakonak izan: lehenengo, argindarra ekoizteko zentral bilakatu zen XX. mende hasieran, eta gero, baserri-etxe moduan egokitu. Ondorioz, eraikin luzanga da, eta fatxada nagusia gailurrarekiko paraleloan kokatua dago, beste etxe gehienetan ez bezala. Gaur egun ikusten duguna duela urte eskas egindako berritze baten ondorio da. Izan ere, behealdean noizbait gehitutako gorputza eta teilapea kendu zioten. Horrez gain, aldamenean zeukan etxolari pisu bat erantsi zioten, jatorrizkoaren fatxadarekin lerrokatuz. Berezitasunik handiena oinarrizko hormak dira eta eguzkira begira irekitako leihoak, egin zireneko sasoiaren arabera aldatuz doazenak.





# Olazarbarria (-a) etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa:



*43° 10' 45"* *2° 36' 3"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

XX. mende amaieran eraikitako etxe berria. *Olazar* (**Ikus Olazarrra**) inguruan kokatzen denez izen hau hartu du, *Olazarrondo* (**Ikus Olazarrondo**) parean eraikita.

Inguruko paisaiari egokituta jasotako txaleta. Solairu bi eta ganbara antzematen dira, fatxada nagusiari erreparatuz gero, eta XX. mende amaierako txaleten tankera igartzen zaio. Horrela, horma guztiak zurituta dauzka, beheko solairua eta tximinia zuloa markatzen duen marra bertikala izan ezik, harriz forratuta baitago. Alboko fatxadan leihoak solairuko argi antolatuta dauden arren, fatxada nagusian ez da hori gertatzen. Aipaturiko tximiniaren marrak muga moduan egiten du, eta hortik ezkerrera zabaltzen dira bao guztiak. Behekoan, ostera, garajearen eta etxearen sarrerak baino ez daude, biak alde batean eta goiko balkoiak babestuta. Balkoira hiru bao zabaltzen dira, eta beste bao bat dago, hortik kanpo. Bukatzeko, ganbaran, teilatuaren ardatzaren alde banatan, bi leiho txiki ditugu, arkuaz burututa.

toponimia

*Garai batean* Olazar *(***Ikusi Olazar***) multzoan barria zen etxea. Hala era gogoan izan behar dugu* Olabarria *ere badugula. Ondorioz, pentsatu behar dugu* Olazar *dela lehenengoa, gero* Olabarria *eraiki zela eta bigarren aldi batean* Olazarbarria*.*



# Olazarrondo etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa:



*43° 10' 44"* *2° 36' 2"* *Berriz Irudiitan / J.A. Ramos*

*Olazarra* (**Ikus Olazarra**) baserriaren lurretan 1970. urtean eraikitako etxea da, eta ordura arte *Olazar* bertan errentero izandako familiarena da. Eraikina nahiko berria izan arren, 2007. urtean berrikuntza batzuk jasan zituen, teilatua eta paretak zaharberritu baitzizkioten.

Oinplano irregularra dauka, bi bolumenez osatua, eta erantsitako garajearen gaina aprobetxatu dute etxearen terraza bertan jartzeko. Etxebizitza lehenengo solairuan dago, eta eskailera batzuen bidez sartzen da bertara, etxea eta terraza ere komunikatzen dituztenak. Fatxadan harria erabili zuten beheko solairuan, eta horma pintatuak goikoan.

toponimia

Olazar *multzoko beste etxe bat, kasu honetan ondoan dagoena (***Ikus Olazarra** *eta* **Olazarbarria***).*





# Otsaita etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Otzáitte / Otzéitte



43° 10' 32" 2° 35' 25" *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*"... la casa principal de Ocheita... en la barriada de Eitua, en Berriz, que es de dos viviendas y se compone enn su piso bajo de portalada con arcos, habitaciones y cuadras; otro alto también con habitaciones y desban; comprende con inclusión del nuevo aditamento antusano o zaguan ciento setenta y nueve y medios estados, equivalentes a seis areas y ochenta y tres centiareas..."*
*DJE 5/72 or. (1882)*

Egun, Abadiñotik Ondarrura doan errepideak banatzen ditu *Otsaita* etxeak. Jatorrizko etxea dugu honako hau, eta haren arnagarekin edo eranskinarekin batera jasotzen da XVIII. mendeko dokumentazioan. Hala, *Ochaita* agertzen zaigu, 1704ko Bizkaiko su-erroldan, eta *Ochaita de Suso*, berriz, 1746koan, beheko partean kokatzen den *Otsaitabeitia* etxetik (**Ikus Otsaitabeitia**) bereizteko. Aurrerantzean, aldaketa gutxi jasan ditu izenak: XVIII. eta XIX. mendeen hasieran, *Ochaita* (1825, PE/1825) aurkitzen dugu, eta *Ochaítas* moduan jasotzen da etxe multzo osoa 1859ko Berrizko Udalak egindako izendegian. Hemeretzigarren mendearen bigarren erdian, bestetik, *Ocheita* (1866, DJE, 2/ 41. or.) eta *Otzeita* (1892, DJE, 6/ 102. or.) erak aurkitzen ditugu. Harrezkero, aldaera hori mantenduko da XX. mendean zehar eta gaur egun arte: *Oxeita* (1905, BUA, 40. or.) eta *Otzeita* (1967, BUA, CE). Ahozkotasunean, berriztarren artean, *Otzáitte* eta *Otzéitte* formak erabili izan dira errepide alboetan aurkitzen diren etxe biak izendatzeko.

Baserri etxe ederra, bizitza bikoa, 1799an jasoa, nahiz eta harlandu zaharragoak dituen osteko fatxadaren oinarrian. Hala ere, nabarmenena bere fatxada nagusia da, guztiz era simetrikoan atondua, indarra jarriaz erdialdean.

toponimia

*Gaztelanian ez daude euskaran dauden soinu batzuk eta horren ondorioz leku izen batzuen idazkera aldatu egiten da denboran zehar. Gure kasu honetan 1704tik 1892ra arteko aipuetan* Ochaita *ageri da eta azken urte horretan, berriz* Otzeita*. Aldaketa honen arrazoia erraz ulertzen da gaur egungo ebakerak* Otzaita *eta* Otzeita *direla baldin badakigu. Jatorrizko soinua* ts *zen eta horregatik eskribauek* ch *idatzi zuten, gero, bizkaieraz soinu hori galdu zen eta* tz *ahoskatzen*





*Otsaita, Guregipuzkoa.net/Portada de la casa solar Oseitza (Otxaita) © CC BY-SS: Ojanguren, Indalecio.*

Ikusgarriak dira atarteko sarrerako bi arkuak. Gainean kokatu zuten, erdian, familiaren armarria inskripzio argigarri batekin, eta bere bi alboetan, leihoak, dena harlanduz egina. Gaineko solairuan, beste bi leiho luze, beheko leihoekin lerrokatuta eta balkoi batekin elkartuak. Eta gorago, ganbaran, bi bao huts. Aldamenetako ardatzetan, leihoak kokatu zituzten, txikitu egiten direnak gora joan ahala. Behekoak, kanpo aldera, burdinazko errejak dituzte.

Etxea harlangaitzaz jaso zuten, ohiko kantalak eta leiho ertzak ezik, baita arku gaineko leihoen eta armarriaren arteko horma ere. Izan zuten asmoa garbia zen, armarriaren aldea indartu gura izan zutelako, beste guztiarekin egin zuen kontrastea areagotuz, gogoan izaten badugu jatorriz harlangaitza estalita eta zurituta zegoela. Bi isuritako teilatua dauka, egurrezko besoek eutsitako hegal zabalekoa.

# Otsaitaldekoa etxebizitza

Aldaerak: Otsaitakzesoria
Ahozkoa: Otzáitte / Otzéitte



*43° 10' 31"* *2° 35' 24"* *Berriz Iruditan / T. Angoitia*

*Otsaita* (**Ikus Otsaita**) dugu jatorrizko etxea, eta honako hau, berriz, nahiz eta egun errepidearen beste aldean gelditu, jatorrizkoaren arnaga edo eranskina baino ez zen, gerora etxebizitza bihurtu zena. Arestian aipatu dugun etxearekin lotuta egon da eraikin hau dokumentazioan, eta, horrenbestez, etxe honen gaineko aipuak eskasak dira. Horrela, 1825ean egindako polizia-erroldan aurkitzen da lehendabiziko aipamena, *Ochaita en su Arnaga*, alegia. XX. mendean aurkitzen ditugu erreferentziarik gehienak: *Oxeita Arnaga* (1905, BUA, 40) eta *Otzeita accesoria* (1967, BUA, CE). Dena den, *Otsaita* sarreran aipatutakoarekin jarraituz, ahozko erabilpenean *Otzáitte* eta *Otzéitte* formak erabiltzen dira beste inolako bereizketarik egin barik bi etxeen artean.

Baserri-etxe apal samarra da, dotorezia irizpidetzat hartzen badugu. Sarri errepikatzen diren bi solairuak eta ganbara ditu. Bao gutxi eta txikiak ditu, ganbarako bi hutsak ezik, eta horietako gehienak obrakoak dira. Banaka batzuk harlanduzkoak dira, baita ukuiluko atea eta alboetako bao batzuk ere. Eraikuntzan erabilitako materiala harlangaitza izan zen. Azkenik, harrietako batean, 1887ko data agertzen da.

toponimia

Otsaita *baserriaren eranskina izandakoa (***Ikus Otsaita***). Bigarren osagaiak aldiz ez du aparteko zailtasunik.* Aldekoa Otsaita *baserriaren aldean dagoen etxea adiera nahi du.*



Cofradia de Eytua. 91.

1. Casa de Olabarria de Dn. Juan de Ybarguen, Vive en ella, y ocupa su
propia Terreria de Olabarria, è Casa mayor.
1. Casa de Arguinzoniz de suso de Juan de Arguinzoniz Vive en ella, yes casa mayor.
1. Casas de Arguinzoniz de yuso, su dueño Josef de Arguinzoniz Vive en ella yes casa mayor.
1. Casa de Yrunza su dueño Juan de Yrunza. Vive en ella, Casa mayor.
1. Casa de Ochoyta de Dn. Francisco de Ochoyta, su dueño Vive en ella, yès Casa mayor.
1. Casa de Sacona que fuè de Juan de Sacona, y se repartiò entre acrehedores, y ès
Casa mayor.
1. Casa de Amezua de Juan de Amezua, Vive en ella, yès Casa mayor.
1. Casa de Larraga de Pedro de Larraga su dueño, Casa mayor, Vive en ella.
1. Casa de Berriz Veytia, su dueño Domingo de Berriz Veytia, Vive en ella yes casa mayor.
1. Casa de Zubia de Pedro de Zubia, Vive en ella Casa mayor.
1. Casa de Lacortu que fuè de Antonio de Lacortu, Vive y ès en poder de Acrehedores,
yès casa mayor.
1. Casa de Aerdi... de Verfano, Vive en ella Juan de Vrioc, yès Casa mayor.
1. Casa de Vriarte de Andres de Vriarte, Vive en ella, yès casa mayor
1. Casa de Yrunza de yuso, de thomas de Yrunza Vive en ella, yès casa mayor.
1. Casa de Ochoyta Veytia de Juan Bauptta. de Abasolo, Vive en ella Andres de
Berroeta Vive Inquilino, yès casa mayor.
1. Casa de Artegui de Juan de Artegui, Vive en ella, yès casa mayor.
½ Casa de Oladea de Dn. Gregorio de Otalora su Inclino Josef de Olaña Casa menor
y media foguera.
⅓ Casa de Errazga de thomas de Yrunza, no hày Inclino pero las tierras las
Ocupan, yès tercia foguera.
⅓ Casa de Martin Perez que ès del Dño Juan de Yrunza. Vive por Inquilino
Ana de Momoytio Viuda, tercia foguera.
⅓ Casa de Francisco de Olaoe de Dn. Bruno de Zabala su Inquilino Juan
de Lauiz, tercia foguera.
½ Casa de Errenaga de Pedro de Errenaga Vive en ella media foguera.
Casa de Mari Gomez, è de Dn. Bruno de Zabala su Inquilina Simona
de Sacona tercia foguera.
½ Casa de Arriaga de Juan Bauptta. de Abasolo, Vive en ella media foguera.
½ Casa de Rementeria Echebarria de Maria de Errementeria Vive en ella
media foguera.
⅓ Casa de Juan Saenz, oy ès de Juan de Arteta Vive en ella tercia foguera.
⅓ Casa de Andres Lopez de Domingo de Larren, Vive en ella tercia foguera.
⅓ Casa de Yturraide cayo, y sus tierras subsisten, tercia foguera.
⅓ Casa de Francisco de Olabarrieta Sametoechea, oy ès de Pedro de Arteta
Vive en ella tercia foguera.
⅓ Casa de Onaindia de Juan Bauptta. de Abasolo, su Inclina Maria de
Albiz, tercia foguera.
¼ Casa de Eytzoa de Juan de Eytuz, su Inclino Juan de Muniche
quarta foguera.
¼ Casa de Zubitueta de Bauptta. de Artelarrea, su dueño Vive en ella, quarta fogra.
¼ Casa de Abaro se halla cayda, sus tierras sin Inquilino quarta
foguera.



# Otsaitabeitia (-a) etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Otéittibéitti / Otséittabeitti / Otzaittebéitti / Otzáittebéti



43° 10' 17" 2° 35' 30" Berriz Iruditan / J.A. Ramos

*"... la casa rústica titulada Otzeitabeitia... del barrio de Eitua de la anteiglesia de Berriz,... se compone de piso llano con zaguan, cocina, dos cuartos y cuadras, mas una tejabana por el lado Este, y de piso principal con un cuarto y tres departamentos destinados a camarote, y mide su planta tres cientos ocho metros cuadrados. Una tejabana horno de pan cocer frente de casa... mide una planta de doce metros cuadrados..." DJE, 6/ 102 or. (1892)*

Bizitza bakarreko baserri honen lehen arrasto dokumentala XVI. mendekoa da, *Ochaita beitia* (1573, BAHP, A178/30.) eta *Ochaita Veitia* (1589, BAHP, A179/30.). Gerora Bizkaiko suerroldetan ere agertzen da *Ochaita Ueytia* (1704). XIX. mendetik aurrera ia aipu guztietan izena jarraian idatzita aurkitzen dugu, *Ochaitaveitia* (1825, PE/1825.) edo *Otzeitabeitia* (1892, DJE, 6/ 102. or.). Auzotarren artean, ahozko transmisioan honako aldaera hauek aurkitzen ditugu: *Otéittibéitti*, *Otséittabeitti*, *Otzaittebéitti* eta *Otzáittebéti*.

XVII. mendean hedatzen hasi zen tankeran jasotako baserria da, apal samarra. Harrizko bi gorputz ditu aldamenetan, eta erdian, material merkeagoekin egindako beste bat. Lehenengoen artean, ezkerrekoa nabarmentzekoa da, bestea baino kalitate hobean jaso baitzen, harlanduen tailuak frogatzen duen moduan. Gainera, kantalean harkantoiak ezarri zizkioten erdiko egurrezko dintelari eusteko; beste aldean ez bezala, bertan egurrezko zutoinaz eutsi behar izan zutelako, *Sarriurizar* (**Ikus Sarriozar**) baserrian gertatu moduan. Harlangaitza nagusi da hormetan. Erdiko gorputzari dagokionez, esan behar harrizko oinaren eta zurezko zutiko baten gainean altxatzen dela. Egurrezko egitura dauka, tarteak harlangaitzaz beteta dituela, luzituta eta zurituta. Bao guztiak leihoak dira, txikienak izanik ganbarakoak eta lehen solairuko aldamenetakoak. Teilatua bi isurkikoa da.

### toponimia

Otsaita *baserrian beheko aldean egindako etxea. Izena ez da berria eta 1573an aurkitu dugu. K. Mitxelenaren ustez* -ita *amaieran izenaren* -i *soinuari gehitutako* -eta *atzizkia zeuden* (Arroita < Arroi+*eta*). *Honek esan nahiko luke izen honen osagaiak* Otsai *eta oso arrunta den* -eta *atzizkia direla.*

# Padura

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Padúre / Padúresarra



*"... la casería rústica titulada Padura... situada en la barriada de Eitua jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprense con su plazuela y huerta contiguas doscientos y cuatro estados cuadrados superficiales de cabida, y la que se compone de una habitación con piso bajo a manera de entresuelo, y de piso alto..."*
*DJE 2/37 or. (1866)*

*43°10'1"* *2°34'27"* *Argazkia: Berriz iruditan*

Desagertutako baserria dugu honako hau, orain dela urte batzuk eraitsi baitzuten. Bizkaiko su-erroldetan aurkitzen ditugu baserri honen gaineko aipamenak, *Padura* (1704, 1745 eta 1796). *Zalduerreka*, alegia, eta Durangora doan bidean kokaturiko baserria zen. Mendeetan zehar, aldaketa gutxi jasan ditu: *Padúra* (1859, BUA, Nmcr) eta Padura (1967, BUA, CE). XX. mende hasieran, *Padura* baserriaren inguruan beste eraikin berri bat egin zen, *Paduraetxebarri* izenez erreferentziatuta agertzen zaiguna: *Paduraechevarria* (1910) BUA, RU) eta *Paduraechevarri* (1967, BUA, CE). Horrenbestez, jatorrizko *Padura* etxea batzuetan *Padura viejo* (1905, BUA, 40) moduan dokumentatzen da. Gerora, *Paduretxebarri* ondoan beste eraikin bat egin zen tailerraren gainean, *Padura chiqui* (1967, BUA, CE) moduan agertzen dena. Dena den, auzotarren artean, inguru hori guztia *Padúre* moduan ezagutzen dute, nahiz eta eraikin guztiak desberdindu: *Padúresarra*, *Padúrebarri* eta *Padúretxiki*.

toponimia

Padura *hitzak bi adiera ditu euskaraz "leku urtsua" eta "uholdeetan ur azpian gelditzen den erreka ondoko ingurua". Bizkaian ez da oso izen arrunta, gure orografia malkartsuak ez duelako errazten horrelakoak egotea, baina Arabako Lautadan, berriz, oso ugaria, sarritan* Madura *moduan ahoskatua. Aurrekoa dela eta inoiz gaztelaniazko hitza pentsatu izan da, harrigarria bada ere.*





*Berriz Iruditan / J. A. Ramos*

XX. mende hasierako etxeak dira, oso soilak. Biak antzeko eskemaren arabera jasoak. Erdian, sarrerako atea; gainean, balkoia eta leihoak, aldamenetan; eta gorengo, ganbara, leiho txikiagoekin. Zaharrena ezkerraldekoa da, harlangaitzez eraikitakoa, eta eskumakoak, ostera, baditu hamarkada batzuk beranduago gustukoak ziren moldura pintatuak, luzitutako hormetan, eta kalitate oneko silarriak kantaletan.

Tailer gainean eraikitako etxea dugu, Euskal Herrian XX. mendeko bigarren erdialdean egin zirenen estilokoa. Etxearen taxuketa sinplea da, nahiz eta bi bolumenez osatuta egon. Nagusiki, oinplano karratuari egokitzen zaio, leihoak ditu fatxadetan zehar eta goiko pisura igotzeko eskailerak alde batean dauzka. Horregatik, beste gorputz txiki bat du erantsita, eta teilatua luzatu zioten, sarrera gisako aterpea eratuz.

# Perdillatza (-a) etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Perdillétza / Pérlitza / Pérllitzena



*43° 10' 8"* *2° 35' 34"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*"... la casería titulada Perdilaza en el termino de la Anteiglesia de Berriz, es de una vivienda, ocupa una superficie con inclusión del antusano y franquicias quinientos veintiocho metros setenta y cinco centímetros..." DJE 4/154 or. (1879)*

Garai batean gotzainaren etxea izandako baserri honen gaineko lehendabiziko erreferentzia Bizkaiko su-erroldetan aurkitzen dugu, *Perdillaza de Uerfano* (1704), hortik aurrera aldaketa gutxi jasan duen izena da. Honako hau, XIX. mendearen amaieran *Perdilatz* (1892, DJE, 6/ 95. or.) topatzen dugu eta egun erabiltzen dena *Perdiletza* (1967, BUA, CE.) Ahozkoetan *Perdillétza*, *Pérlitza* eta *Pérllitzena* aldaerak mantendu dira.

XVII. mendean zabaldu zen tankerako baserrietxea da, hiru gorputzez osatua. Alboetakoak harlangaitzaz eraiki ziren, harlandua kantaletarako utziz. Erdialdean, ostera, atartea dauka, harkantoiek eutsitako egurrezko dintelaren babesean. Horren gainekoa, gaur egun luzituta eta zurituta dagoen arren, bere garaian egurrezko egitura zuen, adreiluzko hormekin tartean. Harrigarri samarra bada ere, beheko solairuak leiho bakarra dauka. Eskuma aldean dago, oso harlandu dotoreez burutua, eta beste aldea itsua da, *Sakona* (**Ikus Sakona**) baserrian legez. Lehengo solairuan, berriz, lau leiho ditu, geroago ezarritako harrizko plaken bidez dotoretuak. Ganbaran, beste bi leiho ditu, ardatzaren alde banatan. Bi isurkiko teilatua duen baserri hau datatzeko, zenbait apaingarri har ditzakegu erreferentziatzat; hain zuzen ere, atartean dagoen ezkerraldeko ateburuan, oinarri baten gainean gurutzea, lorea eta giltzak ikus ditzakegu biribil batean sartuta. Azken elementu hori *Isuntzan* daudenekin pareka daiteke, 1678ko data daramatenak.

toponimia

*Izen hau ia aldaketarik gabe heldu da gurera 1704ko sutegietatik, baina ez da, horregatik argiagoa. Lehenengo osagaia* Perdi *zer den ez dakigu, eta bigarrenerako aukera bi ditugu, latz adjektiboa eta artikulua edo* olatza *"etxola" hitza. Lehenengoak,* latz, *badu arazo bat eta artikulua da. Gure inguruan ohikoa izan da XX. mendean amaierako artikulua galtzea baina kasu honetan ez dugu* Perdiolatz *modukorik bildu 1892ko testigantza bakar batean izan ezik. Aurrekoa ikusita pentsatu behar dugu oinarrian olatza "estola" hitza daukaguna. Soraluze gainean Atseginolatza izeneko baserria dago inguruan* olatza *hitza erabiltzen zenaren lekuko.*



# Sakona (-a) etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Sakóna

*"... la casería rústica titulada Sacona... situada en la cofradía o barriada de Eitua, jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende veinte estados equivalentes a setenta y seis metros cuadrados de planta solar, la que es de una vivienda con sus correspondientes cuadras, divisiones y habitaciones..."*
*DJE 2/164 or. (1868)*

*"... la casería rústica titulada Sacona del barrio de Eitua de la Anteiglesia de Berriz... se compone de piso llano con cocina y cuadras, y de piso principal con tres cuartos y pajar, y encima camarote y mide su planta ciento cincuenta y siete metros cuadrados..."*
*DJE 6/105 or. (1892)*



*43° 10' 21" 2° 35' 20" Berriz Iruditan / A. Arbulu*

*Berrizburu* hegoaldeko magalean kokaturiko baserri honen gainean aurkitu ditugun lehen aipuak XVIII. mendean kokatzen dira. Bizkaiko lehen su-erroldan *Sacona* (1704) aurkitzen dugu, eta horrela mantenduko da gaur egun arte dokumentazioan: *Sacona* (1791, BAHP, A142/5), 1825eko polizia-erroldan ere *Sacona*, eta XX. mendeko udal-erroldetan, *Sacona* (1910 eta 1967). Berriztarren artean, *Sakóna* forma erabiltzen dute ahozkotasunean.

XVII. mendean zabaldu zen tankerako baserri-etxea da, hiru gorputzez osatua. Alboetakoak harlangaitzaz eraiki ziren, harlandua kantaletarako utziz. Erdialdean, ostera, atartea dauka, egurrezko dintelaren babesean. Horren gaineko guztiak (aldamenetako gorputzak barne) egurrezko egitura dauka, adreiluzko hormekin tartean, eta ganbaran, berriz, hutsik daude. Harrigarri samarra den arren, beheko solairuan leiho bakarra dauka. Txikia da eta eskuma aldean kokatuta dago, harlanduekin burutua. Ezkerraldeko horma, berriz, itsua da, *Perdillatza* baserrian legez. Lehenengo solairuan, hiru leiho baino ez daude. Teilatua bi isurkikoa da.

toponimia

*Aparteko azalpenik behar ez duen izena. Euskal Herriko topografia aldapatsuak ekarri du Sakona izen oso arrunta izatea eta hainbat lekutan egoteko izen bereko baserri edo leku. Sakona izeneko etxeak ondoko herrietan ditugu Berriztik kanpo: Kortezubi, Murueta, Arrasate, Bergara eta Zuberoako Domintxaine-Berruetan.*

# Sakonabide

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa:



*43° 10' 16"* *2° 35' 19"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

2013an egindako txalet berria, altura desberdineko gorputz bik osatua. Luzitutako hormak baditu ere, etxearen barrena harrizkoa da. Egurra, ostera, nagusi da baoburu guztietan eta eraikin nagusiaren aurrealdean. Alderik estuenean dago kokatuta eta berau taxutzeko, isuri biko teilatua ere aurreratuta ageri da. Harrizko oinen gainean, zurezko hiru zutiko dauzka, goiko balkoiari eusteko eta erpinean, sasoi bateko egitura imitatzen duen zurajea.

toponimia

*Aparteko azalpenik behar ez duen izena. Euskal Herriko topografia aldapatsuak ekarri du Sakona izena oso arrunta izatea eta hainbat lekutan egoteko izen bereko baserri edo leku. Sakona izeneko etxeak ondoko herrietan ditugu Berriztik kanpo: Kortezubi, Murueta, Arrasate, Bergara eta Zuberoako Domintxaine-Berruetan. Izenaren egiturari dagokionez azpimarratu behar da izena Sakonbidea izan behar zela, azken -a artikulua baita, baina antzina ez bezala XX. mendean ohiko bihurtu zen baserri izenetako artikulua ez galtzea atzean zerbait gehitzean. Getxon, esaterako, antzineko dokumentazioan Ibargoikoa ageri da eta gaur egun, berriz Ibarragoikoa da.*



# San Fausto ermita

Aldaerak:
Ahozkoa:



*43°10'1"* *2°35'13"* *Berriz Iruditan / A. Arbulu*

San Fausto Nekazariaren gorputz ustelbakoa Arabako Kanpezu aldean dago. Kondairak dioenez, agindu zuen hil ostean zaldi gainean igotzeko eta zaldia joango zen lekuan hilobiratzeko. 604. urtean hil omen zen, nahiz eta tradizioz mairuak kristautzen aritu zen. Azken hau ez da posible 711n heldu baitziren Penintsulara. Jai eguna urriaren 14an da.

Durangaldean oso zabalduta dagoen adbokazioa da San Faustorena, Lleidan jaio eta Arabako Bujandan gordetzen den santuarena. Eituako ermita eraikin ederra da, harrizkoa. Tramu bakarrekoa eta presbiterioduna da, eta berorren sarrera moduan, puntu erdiko arku klasikoa dauka, sarrerako arkua bezala. Estaldura gisa, ertz ganga eta labe ganga erabili ziren. Oinaldean, kanpai-horma barrokoa dauka, akroterekin apaindua. Inguruko ermitak lez, portiko edo elizpea dauka bueltan-bueltan. Harlangaitza da usatutako materiala, kantal eta arkuetan ezik. Eta elizpeko teilatua harlanduzko zokalo eta koloma txiki klasikoen gainean eratuta dago. Barrualdea burdinsare metaliko baten bitartez ikusten da, bertan sarrerako atea izanik.





# Txosnagoikoa

desagertuta

Aldaerak: Txosna
Ahozkoa: Txósna



*43° 10' 3"* *2° 35' 39"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*Altzategi* (**Ikus Altzategi**) baserriarekin lotuta egon den etxea dugu hau. Garai batean, etxe nagusiaren eraikin osagarria omen zen. *Altzategi* saldu eta goiko aldean eraiki zuten etxebizitza, orain dela 60 bat urte. Berriztarren artean, hori zein *Altzategi*, *Txósna* izenez ezagutu izan dira.

XX. mende hasierako etxea da, harlangaitzaz jaso zutena, bitarte guztiak zurituz. Bi solairu eta ganbaraz osatutakoa. Eta fatxadak ere bi ardatzetan dituzte atonduta, ganbaran ezik, leiho bakarra dauka eta. Bi isuritako teilatuduna.

toponimia

*Gaur egun jende askorentzat txosnak izaten dira jaietan antolatzen diren behi-behineko tabernak baina txosna bi adiera ditu, batetik behin-behineko eraikuntza (gure egungo txosnak) eta bestetik baserri baten ondoan eraikitzen den bigarren baserria, erdaraz* accesoria *edo* arnaga *moduan ezagutua izan zen. Berrizen, hala ere, bigarren adiera hau ez da sobera erabiltzen eta erdarazko* arnaga *erabili izan da. Azkenik, gogoratu behar da azken urteotan* txozna *idaztea modan egon bazen ere berezko idazkera zuzena* txosna *dela.*

# Zubiazpikoa (-a) etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Subíaxpi



*"... una casería llamada Zubiazpicoa, con su molino,... en la cofradía de Murgoitio, en jurisdicción de la anteiglesia de Berriz, es de dos viviendas y ocupa una planta superficial de ciento treinta y tres estados equivalentes a cinco áreas, seis centiáreas..."*
*DJE 6/158 or. (1893)*

*43° 9' 48"* *2° 34' 41"* *Berriz Irudítan / J.A. Ramos*

*Zalduerreka* ur-emarien ondoan kokaturiko baserri-errota dugu, eta haren gaineko lehen aipuak XVIII. mendean aurkitzen ditugu: *Zubiaspicoa* (1738, BAHP, A123/31. or.). Idazteko formari begiratuta, aldaketa gutxi izan ditu izen honek dokumentazioan, horietan nagusiena delarik batzuetan *S* hizkiaz idatzirik eta besteetan *Z* hizkiaz idatzita agertzea: *Zubiazpicoa* (1825, PE/1825), *Zuviaspicua* (1905, BUA, 40. or.) eta *Zubiaspicoa* (1967, BUA, CE). Auzotarren artean, *Subíaxpi* moduan ezagutzen da.

Elkarren ondoan dauden bi eraikin dira. Bata, txikiena, errotari dagokio, eta obra xumea da, izaera bereko beste eraikin asko legez. Kantalen eta leihoren bat harlanduzkoak badira ere, hormak eta baoak luzituta ditu. Ondoko baserria, ostera, handiagoa da, eta berriztatuta dago. Lau isurkiko teilatu batek babesten du; baina benetan bi zatiz osatuta dago fatxadako leihoek eta materialek ondo adierazten duten moduan. Bi pisuetako baoak neurri desberdinetakoak dira, eta hormak luzituta eta adreiluz estalita daude. Ate nagusia eta kantalak harlanduzkoak dira.

toponimia

*Garai batean* Zubia *izeneko etxe bakarra zegoen baina bigarrena eraikitzeak ekarri zuen berezitu beharra eta* azpikoa *eta* ganekoa *gehitu zitzaien. Hala eta guztiz ere* Azpikoa *beti agertzen bada era goikoari ez zitzaion beti* Zubiganekoa *esan eta askotan* Zubia *huts hutsean ageri zen. Etxe bi dagoen kasuetan hau nahiko arrunta da aski baita bati bereizgarri bat jartzea biak ez nahasteko (*Zubiazpikoa <> Zubia*). Gaur egun zubiak oso arruntak direnez ezin dugu imajinatu zer nolako garrantzia zuten XX. mendera arte. Askotan udal baten diru "galerarik" handiena izaten zen herri zubiak zutik edukitzea eta sarritan egurrezkoak ziren ez baitzegoen harrizkoak egiteko dirurik.*



# Zubiganekoa (-a) *etxebizitza*

Aldaerak: Zubigane
Ahozkoa: Subígane

*"... la casa molino nombrada Zuviganecoa en jurisdicción de la anteiglesia de Berriz, mide la casa una superficie de cuarenta y nueve estados o sea ciento noventa y seis metros cuadrados con su presa, cauce y derechos de agua..."*
*DJE 7/5 or. (1906)*



*43° 9' 53"* *2° 34' 32"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Baserri-errota honen gainean aurkitu dugun lehen aipu dokumentala 1770ekoa da: *Zubiganecoa* (1770, BAHP, A134/1. or.). Hortik aurrera, ia aldaketarik gabe mantendu da izena gaur egun arte. Idazteko orduan aurkitzen ditugu aldaketa bakarrak *S* edo *Z* hizkiaz idaztea dira: *Subiganecoa* (1808, BAHP, A139/10.) eta *Zubiganecoa* (1906, DJE, 7/ 213. or.); forma gehienek, ordea, *Z* darabilte. Auzotarren artean, *Zubigane* moduan ezagutzen da ere, eta hortik dator ahozko forma, hots, *Subígane*.

Baserri eta errota izandakoa da, eta, gaur egun, bizitza biko etxea. 2006. urtean zeharo eraberritu zuten, Berrizko beste baserri zaharrago batzuen itxura emanaz. XVIII. mendeko etxe hau guztiz lunzituta eta pintatuta zegoen. Ez zuen interes handirik sortzen, eta orain, berriz, etxe ederra eta koloretsua bilakatu dute, harria, horma pintatuak, egurrezko egitura eta adreilua konbinatuz. Beheko solairuan harria da nagusi, zaharra zein berria, eta baoetan, egurrezko dintelak zein harria ditu. Lehenengoan, horma luzituak eta egurrezko egitura ditu, adreiluzko hormekin, eta ganbaran, ere, beste horrenbeste. Aurrealde guztian aterpe bat egin dute bi muturretan, fatxadarekiko perpendikular doana, etxe zaharraren ereduari jarraituz. Horretarako, zutoinak dituzte, eta erdian, toskanar kolomak erabili dituzte. Teilatua bi isurkikoa dauka, eta, tarteka, hegalari eusteko, egurrezko habeak ditu.

*toponimia*

*Garai batean* Zubia *izeneko etxe bakarra zegoen baina bigarrena eraikitzeak ekarri zuen berezitu beharra eta* azpikoa *eta* ganekoa *gehitu zitzaien. Hala eta guztiz ere* Azpikoa *beti agertzen bada era goikoari ez zitzaion beti* Zubiganekoa *esan eta askotan Zubia huts hutsean ageri zen. Etxe bi dagoen kasuetan hau nahiko arrunta da aski baita bati bereizgarri bat jartzea biak ez nahasteko (*Zubiazpikoa <> Zubia*). Gaur egun zubiak oso arruntak direnez ezin dugu imajinatu zer nolako garrantzia zuten XX. mendera arte. Askotan udal baten diru "galerarik" handiena izaten zen herri zubiak zutik edukitzea eta sarritan egurrezkoak ziren ez baitzegoen harrizkoak egiteko dirurik.*

# Zubitoeta

etxebizitza

Aldaerak: Zubitxueta
Ahozkoa: Zubítxueta / Górroñona



43° 10' 1" 2° 35' 17" *Gerediaga Elkartea / Txelu Angoitia*

*"... la casería llamada Zubitoeta, en jurisdicción de la anteiglesia de Berriz, próxima a la ermita de San Fausto,... ocupa una planta solar de sesenta y cuatro estados, se compone de piso llano, principal y desban..."*
*DJE 6/39 or. (1891)*

*Zalduerreka*tik gertu dagoen baserri honen gaineko lehen aipamenak XVII. mende amaieran jasotzen ditugu: *Zubitoeta* (1677, BAHP, A791/32). Baserri honen izenak aldaera gutxi izan ditu dokumentazioan, aldaketa bakarra delarik -*ttoetta*, -*toeta* edo -*tueta* amaierarekin agertzea: *Zubittoetta* (1788, BAHP, A202/4. or.), *Zubitoeta* (1825, PE/1825) eta *Zubitueta* (1873, DJE, 3/ 91. or.). Beste ba-tzuetan, *B-z* beharrean *V-z* rekin agertzen baita idatzita: *Zuvitoeta* (1905, BUA, 40. or.). Berriztarren artean, *Zubítxueta* edota *Górroñona* moduan ezagutzen da. Sarreran, *Zubitxueta* izena dago zizelkatuta letra larriz, xafla batean.

1800. inguruan egiten ziren tankeran jasotako baserri etxea da. Arku ederraren bitartez sartzen da atartera, fatxada nagusiaren erdian dagoena. Honen alde banatan, leihoa. Lehenengo solairuan, aurrekoekin lerrokatuta, leihoak, eta erdialdea indartuz, leiho bi elkarren ondoan, arkuaren gainean. Harlangaitza erabili zuten hormak egiteko eta kalitatezko harlandua, kantal eta baoetan. Ganbara aldea, ostera, egurrezko egituraz armatu zuten eta tarteak luzituta ageri dira. Bi isuritako teilatua du, miru buztana deritzana gehituta.

toponimia

*Leku izen ederra bere osaketarengatik.* Zubitxuak, *izenak berak dioen bezala, zubi arruntak baino txikiagoak ziren, baina haien desberdintasunik handiena erabilera zen. Zubi arruntak ez bezala pertsonentzakoak eginak ziren ez abereak ez gurdiak pasatzeko eta sarritan egurrezko habeak baino ez ziren. Beste batzuetan, aldiz, harlauzez egiten ziren. Askotan errekako ibi batean zeuden eta horrela abere eta gurdien ondotik igarotzen zuen jendeak. Kasu honetan -eta atzizkia lekua besterik ez du adierazten, eta ez ugaritasuna. Dokumentazio zaharrean* Zubito *dugun arren gaur egun* Zubitxu *da.*

# Murgoitio

*Aingeruena*
*Arboletanagusia*
*Arboletatxikia*
*Arritegi*
*Arroita*
*Arroitajauregi*
*Arroitaonaindia*
*Arroitaetxetxikia*
*Boliñate*
*Done Joanes*
*Etxanoeta*
*Etxanoetaurre*
*Flores*
*Gomendio*
*Gomendioetxebarria*
*Gomendiourrutia*
*Gomendiourigoen*
*Gomendiouriarte*
*Gomendioizagirre*
*Loitzate*
*Loitzatebarria*
*Murgoitiobeña*
*Beñandikoa*
*Murgoitioamandarro*
*Nikolasena*
*Solaburu*
*Uribelebarieta*
*Lebarieta*
*Zelaieta*
*Zelaietazpikoa*
*Zubierrementaria*

# Aingeruena etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa:



*43° 9' 18"* *2° 33' 59"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Murgoitio auzoan aurkitzen dugun txalet berri hau 1997. urtean eginda dago. Elorriorako bide ondoan kokaturik dago, *Done Joanes* (**Ikus Done Joanes**) ermitara eta auzoaren goiko aldera igotzeko bidegurutzean, *Loitzateberri* (**Ikus Loitzateberri**) baserriaren parean. Orain arte izenik gabe egon den arren, duela 6 bat urte urdin kolorez margotu zenetik, herritarren artean *"pitufo-etxea"* izenez ezagutu izan da. Arroita baserri multzoen beheko soloetan kokatzen da.

Euskal Herriko Hegoaldean, XX. mendearen azken hamarkadetan asko hedatu zen estilo euskal-landatarrean taxutua dago etxea. Teilatua bi isurkitakoa da, eta fatxada oso modu simetrikoan antolatuta dago. Beheko solairuan, aterpea, ateak eta leihoak ditugu, eta goikoan, berriz, balkoi luzea, batasuna emanez bizitza biko etxeari.

## toponimia

*Aitzitik, izen berria, zorionez, euskal sistemari jarraiki eratu da, Bizkaiko sistema erabili beharrean Nafarroakoa erabili bazuen ere. Izenaren osagaiak dira: "Aingeru" izena eta "etxe" esangura duen* -enea *atzizkia (atzizkia, izatez,* -ene *da, eta, amaieran, artikulua jartzen zaio). Bizkaian* -ena *da horrelakoetan erabiltzen den egitura, eta Berrizen bertan, horren adibide ditugu* Nikolasena *(***Ikus Nikolasena***) eta* Gasparrena *(***Ikus Gasparrena***).* Aingeru *hitza, eta pertsona izena, osoa zaharra da gurean. Grezierako* ángelos *("mezularia") hitzetik, latinezko angelus sortu zen, eta hortik, euskarazko* aingeru *eta gaztelaniazko ángel. Izenak izan duen zabalkunde handia Aingeru Guardakoari zor zaio; izan ere, izen hori ematean haurra babestuago egongo dela uste da. Hala ere, XX. mendean Sabino Aranak asmatu zuen Gotzon izena, eta horrek ia erabat ordezkatu zuen Aingeru eguneroko erabileran.*



# Arboletanagusia etxebizitza

Aldaerak: Arboleta
Ahozkoa: Árboleta / Arbóletaaundixe / Arbóletanagusia

*"... la casería de Arboleta, su accesoria y pertenecidos radicantes en la cofradía de San Bartolomé de Miota jurisdicción de la vila de Elorrio cuya descripción es como sigue. La caseria de Arboleta señalada con el numero veinte y dos, es de una vivienda, componiéndose en el piso bajo de cocina, cuartos dormitorios y cuadra, habitación superior tambien con dormitorios pajares y camarote..."*
*DJE 7/40 or. (1877)*



*43° 9' 39"* *2° 33' 42"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Murgoitioko *Done Joanes* (**Ikus Done Joanes**) auzoaren goiko aldean, eta urtez Elorriokoa izandakoa, dagoen baserri honen aipuak XVII. mendekoak dira, *Arboleta, dos casas de* (BFA, duel, 235, 2929, 12 or.). Aipuek baserriari eta horri zegokion eraikin gehigarriari erreferentzia egiten diete. Bizkaiko su-erroldetan ere jasotzen dira etxe horiek *Borleta* (1704) edota *Arboleta* (1746) izenekin. 1883. urtean aipatzen da lehenengoz baserria eta aipatutako eraikin gehigarria: *Arboleta y accesoria* (BFA, duel, 121, 1553 (1), 16 or.). XX. mendean ere, *Arboleta* (1925, BFA, duel, 10, 129, 1 or.) eta haren inguruko etxeak aipatzen dira (BB, Arregi, G., 1987, 139 or.). Auzotarren artean, ahozko transmisioan, *Árboleta*, *Arbóletaaundixe* eta *Arbóletanagusia* formak aurkitzen ditugu baserriari erreferentzia egiterakoan.

Baserri barroko ederra da. Bi isurkitako teilatua dauka, eta guztiz simetrikoa den fatxada nagusi bat. Sarrerako bi arkuek ematen dioten dotoreziak bat egiten du erdialdeko leihoak antolatzeko erabilitako moduarekin. Izan ere, etxearen alturari guztiz egokitzen zaizkio lehen pisuko bi leihoak eta ganbarako txikiena. Alboetako bi gorputzak ere modu berean atondu ziren: handienak beheko solairuan, eta txikiagoak, goikoan. Etxearen kalitatea nabarmen indartzen dute arkuen eta leihoen inguruko harlandu bikainek. *Loitzate* (**Ikus Loitzate**) etxearen antz handia du fatxadaren antolamenduak. XVIII. mende hasierakoa izan daiteke.

toponimia

*Leku-izen honen osagai argiak dira:* Arboleta *leku-izena eta* nagusia *adjektiboa, etxe hau izen bera daramatenen artean garrantzitsuena delako. "*Arboleta*" izena deigarria da, ez baita arrunta arbola hitza gure toponimian agertzea,* zuhaitz, zugatz *eta horrelakoak baizik. XVIII. mendean, esaterako, ez da Bizkaiko baserrien zerrendetan Arbolantxa besterik agertzen. Izenaren beste osagaia ugaritasuna edo lekua adierazten duen* -eta *atzizkia da.*

# Arboletatxikia etxebizitza

Aldaerak: **Arboleta**
Ahozkoa: **Árboleta**



*43° 9' 38"* *2° 33' 43"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*Arboletanagusia* (**Ikus Arboletanagusia**) jatorrizko baserriaren aurrealdean XX. mende hasieran eraikitako bizitza bakarreko baserria dugu. Kasu honetan, eta Berrizen ohitura izan denaren kontra, eraikin gehigarria bizitza bihurtu beharrean, aurreko partean eraiki zuten bizitza berria. Auzotarren artean, honako hau ere *Árboleta* moduan ezagutu eta ahoskatzen dute, nahiz eta jatorrizkotik bereizteko *Arboletatxikia* izena izan.

XIX. mende amaieran eta XX. mende hasieran eraikitako baserri gehienen antzera, ez du arkurik, eta, zabalera baino gehiago, altuera eman zioten. Bi isurkitako teilatua dauka, eta etxearen ardatza argia da: atea erdian, balkoia lehenengo pisuan eta leihoa ganbaran. Alboetan, leiho bana daukagu solairuko, eta kontraste ederra egiten dute hormen kolore zuriarekin etxearen ertzetako, ateko eta leihoetako harlanduek.

toponimia

Arboleta *ondoan eraiki zen etxe berri honek, Bizkaiko usadioari jarraiki, lekuaren izena eta etxea bereizteko ezaugarri bat hartu zuen: kasu honetan, "txiki" adjektiboa (***Ikus Arboletanagusia***).*



# Arritegi

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: **Arratai**

*"... la casa accesoria [de la casería principal de Arroita] conocida con el nombre de Arritegui se halla... en la misma barriada de Murgoitio... comprende una vivienda con sus correspondientes repartimentos y local para el uso de labranza; miden la planta y antuzano tres áreas, cuatro centiáreas, treinta y tres decímetros y noventa y dos centímetros, igual a ochenta estados..."*
*DJE 5/37 or. (1881)*



*43° 9' 28"* *2° 34' 4"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Baserri honen gaineko lehen arrasto dokumentala 1825ekoa da, *Arritegui* agertzen baita poliziak egindako erroldan, Murgoitio kofradiari dagokion baserriari erreferentzia eginez. Auzokoen zein herritarren artean, baserri hau *Arrátai* moduan ezagutzen da. XIX. eta XX. mendeetan zehar Udalak egindako erroldek erakusten dutenaren arabera (1857, 1905 eta 1967), bizitza moduan erabili arren, egun baserria hutsik eta erdi-erorita dago, sasiak estaltzen dutelarik. Berriz eta Elorrio lotzen duen errepidearen bazterrean kokatuta dago.

Erdi erorita dagoen arren, gordetzen ditu atzeko hormak eta fatxadaren zatiren bat. Ate-ingurua nolakoa izango zen ezin izan dugu ikusi; baina, geratzen diren aztarnetatik abiatuta, esan genezake XIX. mende amaierako eta XX. mende hasierako etxeen antza duela: hiru ardatzetan antolatuta, balkoiak erdian (hormigoizkoa eta ganbarakoa), eta leihoak, alboetan, azkeneko solairukoak izanik txikienak. Harlanduzkoak dira bao inguruak eta etxearen kantalak; hormak, ostera, luzituta eta margotuta daude.

toponimia

*Itxuraz, izenak ez du bestelako azalpenik behar.* Arritegui *izenaren osagaiak dira: "harri" hitza, eta "toki" esan nahi duen* -tegi *atzizkia. Hala ere, ez da arrunta XX. mendeko etxe batean egitura hori agertzea, eta pentsa genezake oinarrian Gipuzkoako Gazteluko Arriategi deitura dagoela. Ahoz erabiltzen den izena, hots,* Arrátai, *inguruko ohiturari jarraiki eratu da, tarteko -g- hizkia desagertzeaz gain, bokalen arteko armoniak* Arratai *sortu baitzuen.*

# Arroita

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: **Arróitte / Arróittebe**



*43° 9' 25"* *2° 33' 55"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*"... la casería llamada de Arroita radicante con sus pertenecidos en la anteiglesia de Berriz,... en la barriada de Murgoitio... consta de dos viviendas con sus correspondientes cocina y demás repartimentos, cuadras y mucho local para el uso de labranza; es de construcción antigua, pero las obras se hallan solidas y en buen estado; mide su planta, la del orrio, antuzano y franquicia de su frente ocho áreas, cuarenta centiáreas, setenta decímetros y setenta y tres centímetros, que equivalen a doscientos veinte y un estados..."*
*DJE 5/37 or. v (1881)*

Inguruko baserriei izena ematen dion baserri honen gaineko aipuak XVII. mendearen erdialdean kokatzen dira: *Arroita* (1642, BAHP, A1201/32). Gerora, dokumentazioan forma bera mantendu du, batzuetan -t bikoitzaz agertu bada ere: *Arroita* (Bizkaiko su-erroldetan), *Arroitta* (1792, BAHP, A269/5) eta *Arróitas* (1859), Berrizko Udalak egindako Nomenklaturan. Beraz, aldaketarik gabeko baserri-izen baten aurrean aurkitzen gara. Berriztarren artean, *Arróitte* moduan ezagutzen da, eta izen bera erabiltzen dute zona honetako baserri-auzoa identifikatzeko.

XVI. mendeko silarridun hormak gorde dituen baserri handia da, nahiz eta haren tipologia XVIII. mendekotzat jo daitekeen. Solairu bi eta ganbara ditu, eta atarteko arku ederrak eta haren gainean zabaltzen diren harlanduzko bi leihoek gaur egungo baserriaren itxura indartzen dute. Erdialdeko eta eskumako hormak harlangaitzez egin ziren, eta kontraste bizia egiten dute ezkerraldean bista-bistan dituen kalitate oneko silarri zaharrekin. Bi isurkitako teilatua dauka, eta baoen banaketa ez da simetria ardatzaren arabera egin.

toponimia

*Izen iluna dauka, zaharrak diren beste askok bezala. Mitxelenaren ustez, lehenengo osagaia* arroi *edo* arroil *("mendien arteko sakana") hitzaren aldaera izan daiteke, eta amaieran* -eta *atzizkia dugu:* Arroieta > Arroita*. Hala ere, antzekoa den* Besoita *ikusita ez da hain gardena azalpen hau.*



# Arroitajauregi

etxebizitza

Aldaerak: Landena / Jauregi
Ahozkoa: Arróitajáuregi / Jáuregi / Landena

*"... la casería de Landa arroitajauregui y pertenecidos radicante en la Cofradía de Murgoitio jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz... es de dos viviendas y se compone de piso bajo con dos cocinas, dos cuartos y portalada con cuadras; principal con sus salas y cuartos dormitorios; y además dos camarotes y pajares. Ocupa con inclusión del horno y zaguan ciento ochenta dos estados o seis áreas y noventa y dos centiáreas..."*
*DJE 4/78 or. (1879)*



*43° 9' 24"* *2° 33' 53"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Bizitza biko baserri honen gainean topatu dugun lehendabiziko erreferentzia 1704koa izan arren (*Arroyta Jáuregui)*, badakigu baserria zaharragoa dela eta XVI. mendean gutxienez kokatu behar dugula. 1704an hasi eta gaur egun arte errolda guztietan *Arroita Jauregui* moduan agertzen bada ere, bertakoek *Jáuregi* esaten diote, familiaren abizena, alegia; horrez gain, *Landena* moduan ere ezagutzen da.

XIX. mende hasieran, erre ondorenean, jaso bazuten ere, Berriz inguruan aurreko mendean ohikoa zen tipologian eraiki zen, altueran nabarmenduz bereziki denboraren joana, solairu bat gehiago erantsi baitzioten eta leihoak gehitu eta haunditu. Hala ere, lehenengoa da dotoreena, balkoiaren burdineriak eta leihoen neurriak argi adierazten duten moduan. Betiko legez, simetrikotasuna da ezaugarria. Ardatzean, sarrerako arkua, gainetiko balkoiek eta ganbarako leihotxoa. Albo banatan, bina leiho, bata bestearen gainean, txikienak bigarren pisukoak izanik. Arku eta leihoen inguruko hareharri koloretsuak oso kontraste ederra egiten du fatxada zuriarekin.

toponimia

*"Arroita" toponimoaz eta "jauregi" hitz arruntaz osatutako izena. Bizkaian ohikoa da baserriak multzotan agertzea, eta auzunearen izenaz hornituta. Kasu honetan, etxe hau* jauregi *bat izan zela adierazten zaigu. Ahozko ebakeran, arruntena da bigarren osagaia baino ez erabiltzea eta izen osoa gutxietan erabiltzen da, nahasteko aukera dagoen kasuetan baino ez (*Arroitajauregi *eta* Trañajauregi *desberdintzeko, esaterako).* Landena *izena berria da, eta bertakoen deitura erabiliz sortu zen. Bizkaian oso arruntak dira -ena amaiera duten etxe izenak; baina berriagoak dira Nafarroan baino, eta, horregatik, ez dute deiturarik eman. Horrelako izenak etxe kopurua nabarmen handitzean sortu ziren, eta oinarrian, jabearen edo bertan bizi zenaren ezizena, deitura edo lanbidea dute.*



# Arroitaonaindia (-a) etxebizitza

Aldaerak: Onaindi / Arroitabe / Arroitabeiti / Askarreta / Onandia
Ahozkoa: Ónandidxe




*43° 9' 23"* *2° 33' 56"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*"... la casa llamada Arroita-onandia... en la cofradía de Murgoitio en Berriz ocupa una planta solar de ochenta y siete estados cuadrados, equivalentes a tres áreas y treinta y un centiáreas con inclusión de los aleros..."*
*DJE 6/10 or. (1890)*

Topatutako lehen arrasto dokumentala 1659koa da: *Arroitta Onandia* (BAHP, A417/32). Bertan, Murgoitio kofradiaren baitan agertzen den baserri bati erreferentzia egiteko erabiltzen da izen hori. Beraz, XVII. mendetik aurrera, baserri honen inguruko aipuak aurkituko ditugu dokumentazioan. *Done Joanes* ermitara doan bide bazterrean kokatzen da baserria, *Arroitak* moduan ezagutzen diren beste bi baserrirekin batera: *Arroita* (**Ikus Arroita**) eta *Arroitajauregi* (**Ikus Arroitajauregi**). Antza, aipaturiko hiru etxe horiek osatzen duten multzoa *Askarreta* moduan ezagutzen zen garai batean. Horrela, 1868ko jabego-eskritura batean izen hau aurki dezakegu: *Ascarreta onandia* (1868, DJE, 2/ 154. or.). Etxearen aurrealdean beste eraikina dago, auzotarren artean *Etxetxikia* izenez ezagutzen dena (**Ikus Arroitaetxetxikia**).

XIX. mendean zehar, egiturak sinplifikatzeko eta soiltzeko joera izan zen, eta horrela igartzen da baserri etxe honetan, guztiz apurtzen baitu fatxadaren erdialdea indartzeko ordura arteko ohitura. Hala, ateburudun sarrera eta gaineko balkoia ere alboan kokatzen dira. Leihoen antolamendua, ostera, betikoa da: neurri berekoak denak ganbarako alboetakoak izan ezik, txikiagoak direlako. Azkeneko berriztatze-lanetan harlangaitza desestali diote, jatorrian harriz estalita, luzituta eta pintatuta zegoena lau izkinetan izan ezik, horko harlanduek argi uzten duten moduan.

## toponimia

Arroitajauregi *etxearen kasuan bezala, auzo-izenaz +* etxearen *izena egituraz osatuta dago toponimoa. Bizkaian, bereziki Durangaldean, oso arrunta da egitura hori, eta horrela sortu ziren Euskal Herriko deiturarik luzeenak. Kasu honetan, "beste aldean dagoena" adierazi nahi du. Horrelako izen luzeak laburtu egiten dira, eta auzoaren zatia ez da erabiltzen, antzekoa den beste batetik berezi behar ez bada. Horiez gain, beste izen bi baditu:* Arroitabe *edo* Arroitabeiti *eta* Askarreta Onandia*.* Arroitabe *eta* Arroitabeiti *izenak beste etxeekiko kokapena deskribatzen du, beherago baitago; aitzitik, izen hori XX. mendekoa da. Azkenik* Askarreta *izenaz ezagutzen da jatorrizko* Arroita *gunea.* Azkarra *edo* askarra *zuhaitz txikia da,* Acer campestris*, hain zuzen ere, eta egun urria bada ere, oso zabalduta egon da Bizkaia osoan.*



# Arroitaetxetxikia (-a) etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Etxetxikia

*"... la casa accesoria [de la casería principal de Arroitaonandia] llamada arroita-onandia-echevarria... [en la cofradía de Murgoitio en Berriz] ocupa una planta solar de treinta y seis estados cuadrados..."*
*DJE 6/10 or. (1890)*



*43° 9' 22"* *2° 33' 57"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*Arroitaonaindia* (**Ikus Arroitaonaindia**) baserriaren aurrealdean aurkitzen dugun eraikina dugu honako hau, Murgoitio auzoko goialdera doan bidearen kontran dagoena. Hasiera batean baserriaren biltegia izango zena, XIX. mende amaieran (*Arroita onandia echevarria, 1889*) eta XX. mendearen hasieran (*Onandia casa nueva, 1905*) etxebizitza moduan agertzen zaigu. Auzotarren artean, *Etxetxikia* izenez ezagutzen da.

Etxe soila da, XIX. mendeko tendentzia garbizale neoklasikoari jarraituz. Bi isurkitako teilatua dauka, eta honela egituratzen da: atea erdian; alboetan leiho bana, baita lehenengo solairuan ere, eta azken pisuan, erdian, leihotxoa. Harlanduz egindakoa da; baina baoetan indartu egin zuten materialaren presentzia, silarrien neurria handituz eta ateburua eta leihoburuak pieza bakarrekoak eginaz. Horien kolore argiagoak, gainera, are gehiago bereizten ditu.

toponimia

*Aparteko azalpenik behar ez duen izena dugu hau. Hala ere, euskal sistema jatorrari jarraiki,* Arroitaetxetxikia *izena hartu du etxe honek.*

# Beñandikoa etxebizitza

Aldaerak: Andikoa
Ahozkoa: Béñeandikue



*"... la casería rústica titulada accesoria de Murgoitioveña... situada en jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz [Cofradía de Murgoitio], que comprende cuarenta y nueve estados equivalentes a un área y ochenta y seis centiáreas de cabida, y la que se compone de piso bajo con cocina, un dormitorio, cuadras y una tejabana, y de piso principal con desban..."*
*DJE 2/154 or. (1868)*

*43° 9' 42"* *2° 33' 51"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*Murgoitiobeña* (**Ikus Murgoitiobeña**) baserriaren alboko etxea, dokumentazioan *arnaga* edo *accesoria* moduan erregistratzen dena. Gerora baserri-etxea bihurtutako eraikin honen inguruko lehen aipuak XIX. mendean aurkitzen ditugu: *Beña-arnaga* (1865, DJE, 1/ 102. or). Ordurako, bizileku moduan funtzionatzen zuen. XX. mendeko aipuek, aldiz, *Beña accesoria* (1910, BUA, RU) izenez jasotzen dute. *Done Joanes* (**Ikus Done Joanes**) aldeko auzotarrek, ostera, *Andikue* edo *Béñeandiku*e izenez ezagutu eta ahoskatzen dute.

Etxeak hiru isurkitako teilatua du, eta XIX. mende amaieran berreraiki zuten etxea. Fatxada oso era sinplean ordenatu zuten, hiru ardatz eratuz eta baoen neurriak solairuen arabera egokituz. Atea albo batean dagoen arren, erdialdea nabarmentzen da, bata bestearen gainean kokatutako balkoien bitartez. Aldamenetan, leihoak ireki zituzten: neurri berekoak dira beheko eta lehen solairukoak, eta txikitxoagoak, aldiz, ganbarakoak. Bertan, alderik alde doan balkoia egin zioten beranduago, bertikaltasuna hausten duena. Azpimarratzekoa da horma zuriak eta ertzetako harriek egiten duten kolore-jokoa.

## toponimia

*Murgoitiobeña (***Ikus Murgoitiobeña***) baserriarekin lotura zuzena duen toponimoa da, eta "Beña baserriaren beste aldean dagoen etxea" esan nahi du. Etxe berria da, eta dokumentuan* accesoria *edo* arnaga *kalifikazioaz ageri da. Gaztelaniaz, horrela deitzen zitzaien etxe nagusi baten ondoan eraikitzen zen etxetxo berriari, euskaraz* etxetxo *edo* txosna *deitzen zena. Izenaren bigarren osagaia,* handi*, arrunta da oso gure toponimian, eta inoiz 'nagusi' hitzarekin nahastu izan da.*



# Boliñate

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Bolíntxu / Bólinena

*"... la casería denominada Bolinate... sita en la barriada de Murgoitio, jurisdicción de la anteiglesia de Berriz, consta de una vivienda y ocupa treinta y medio estados de planta solar, o sean ciento diez y seis metros cuadrados con inclusión del horno y tejavana y antusano o franquicias contiguas; se compone en su piso llano de portalada, cocina, aposento y cuadra; en el piso principal de dos dormitorios y pajar, y encima de los dormitorios pajar..."*
*DJE 5/31 or. (1881)*



*43° 9' 52"*    *2° 34' 31"*    *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Baserri hau XVIII. mendeko su-erroldetan agertzen da: *Boliate* (1704), *Volinate* (1745) eta *Bolinarte* (1796). XIX. mendean *Bolinate* moduan dokumentatzen da, eta XX. mendean *Bolinete* izatera pasatu zen, horrela agertzen baita Udalaren erroldetan (1910 eta 1967). Azken berriztapenekin, 1980eko hamarkadan, *Bolintxu* izena agertzen da, ate nagusiaren goialdean jarrita duelarik. Auzotarren artean, baserri-taberna izandako eraikin hau *Bolíntxu* edo *Bólinena* moduan ezaguna da. Murgoitio eta Eitua kofradiak bereizten dituen *Zalduerrekaren* ondoan kokatuta dago, *Zubierrementari* (**Ikus Zubierrementaria**) baserrira heldu baino lehen.

Etxe xumea eta soila da, XIX. mendeko amaieran eta XX. mende hasieran nagusitu zen estiloaren baitakoa, eta bi isurkitako teilatua dauka. Nahiz eta lehen begiratuan simetrikoa dirudien, fatxada nagusiko baoak alde batera daude, ganbarako leihotxoek frogatzen duten moduan. Antolamendua sinplea da: atea erdi antzean, eta pisu bakoitzeko leiho bana, alboetan. Tradizioak agintzen zuen moduan, harlandua nabarmentzen da lau kantoietan, nahiz eta ate inguruan ere izan, erdi ingururaino.

toponimia

*Mendebaldeko Euskal Herrian* errota *deitzen dugun eraikuntza lehenago* bolu *edo* boli*, deitzen zen, eta nonahi ikus dezakegu hitz horrekin osatutako toponimoak:* Bolibar, Bolueta Bolunburu... *Hitz biek, 'errota' eta 'bolu', latina dute jatorri. Latinezko rota hitzetik* errota *sortu zen euskaraz eta rueda gaztelaniaz. Modu berean, latineko* molinum *hitzetik gaztelaniazko* molino *eta euskarazko* bolu *sortu ziren.*

*Antzina, hitz horrek* -n- *zuen tartean, hau da,* bolinu*; baina, euskarazko zenbait hitzetan, bokalen artean ageri zen -n- soinu hori galdu egin da. Horrela gertatzen zen bai leku-izenetan (*Otxandio, Zestoa...*), bai euskarazko hitzetan (adib. ardoa eta gazta), eta baita latinetik hartutakoetan ere (*katea *eta* kanpai *latinezko* catena *eta* campana *hitzetatik datoz, hurrenez hurren). Aitzitik, hitz konposatuetan berriro ageri da -n- hori, eta horregatik esaten dugu* katenbegi, kanpandorre, ardandegi *eta* gaztanbera*, besteak beste.* Bolu *hitzaren kasuan ere, horregatik ageri da hemen eta* Bolunburu *izenean* -n- *hori. Horrenbestez,* 'Errotako atea' *esango genuke gaur* Bolunate*-ren ordez. Baserriaren beste izenak, hots,* Bolintxu *eta* Bolunena*, berriagoak dira, eta jatorrizko* Bolinate *izenetik sortu ziren. Gogoratu behar da* Boliñate *esaten zitzaiola.*





# Done Joanes ermita

Aldaerak: San Juan
Ahozkoa:



*43° 9' 41"* *2° 33' 53"* *Berriz Iruditan / A. Arbulu*

Murgoitioko kofradiaren ermita San Juan Bataiatzaileari dedikatutakoa da. Oinplano luzenka, tramu bakarra eta burualde zuzena dauka, baita sarreran atrio moduko bat, harrizko jarlekuekin, alboetako hormak luzatuta lortu dena. Inguruko ermiten antzera, elizpea dauka inguratzen. Berorren teilatuari eusteko, koloma klasiko arinak daude aurrealdean; eta aldamenetan eta ostean, harrizko zokaloa eta egurrezko zutikoak. Harlangaitza da nagusi eraikinean, baina kantaletan harlandua erabili zuten. Barrualdea ikusi ahal izateko, aterpean zokaloa eta egurrezko hesia daude, eta honetan, atea.

## toponimia

*Done Joanes Bataiatzaileak gurtza handia izan du Euskal Herrian, eta, horregatik, badu euskarazko izen berezia, tradizio handiko beste santuek bezala (Done Jakue, Done Petri...). Tamalez, XVI. mendeko Trentoko kontzilioaren ostean, santuen euskal izenen erabilera gutxitzen joan zen, eta gehienetan, desagertu edo zokoratu egin ziren. Abadiñoko San Bizente baselizaren aurreko baserria Done Bikendi da (San Bizenteren izen jatorra), eta Mikeldi izena agertzea Durango San Vicente ermitaren ondoan ez da arraroa, Bikendiren ahozko aldaera delako. Ahozkoan ere, Bizkaian arrunta zen "*Donien atxa*" deitzea Done Joanesen enborrari.*



# Etxanoeta

etxebizitza

Aldaerak: Etxanoetak
Ahozkoa: Étxanuétak

*"... la casería rústica titulada Echanoeta... situada en jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende con su casa accesoria llamada Arnaga... que se hala en frente, su horno, huerta y antusanos cuatrocientos treinta y dos estados, equivalentes a mil seiscientos cuarenta y tres metros de cabida, la que se compone de piso bajo y alto, con sus correspondientes cuadras, divisiones y habitaciones..." DJE 3/59 or. (1872)*



*43° 9' 37"* *2° 34' 7"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Topatutako lehen arrasto dokumentala 1704koa da, bertan Murgoitio kofradiaren baitan agertzen den baserri bati erreferentzia egiteko erabiltzen baita izen hau. Izenari dagokionez, beti *Echanoeta* moduan erregistratu da. Parean duen etxebizitza eta beste hau *Étxenuétak* moduan izendatzen dituzte auzokoek, nahiz eta bestea *Etxanoetaurre* (**Ikus Etxanoetaurre**) izan.

Baserri-etxe ederra dugu, XVIII. mendean nagusitu zen estilokoa, eta bi isurkitakoa. Fatxadak, ohikoa den legez, erdialdea du indartuta, hau da, sarrerako arku apainak giltzarrian gurutzea dauka eta gainean solairuko bi leihoak eta ardatzaren puntan, ganbarako leihotxoa daukagu. Alboko gorputzetan, berriz, beheko solairuek leiho bana dute, eta baita gaineko pisuak ere, txikiagoak, ordea. Badu tartean beste leiho bat, beranduago egina, bista-bistan dagoena. Harlangaitz luzitua erabili zuten eraikinean, eta kalitateko harlandua, berriz, arkuen eta leihoen ertzetan. Teilatu-hegalari eusteko habeek ere ematen diote berezkotasuna etxeari.

toponimia

*Leku-izen honen osagaiak argiak dira: batetik, "etxe" hitza, konposatuetan* etxa- *bihurtzen dena; bestetik,* -no *txikigarria, gaur egungo* -txu *eta* -txo *atzizkien parekoa; eta, azkenik, lekua edo ugaritasuna adierazten duen* -eta *atzizkia.*



# Etxanoetaurre etxebizitza

Aldaerak: Etxanoetak
Ahozkoa: Étxanuétak



*43° 9' 36" 2° 34' 6" Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Dokumentu guztietan, baserri hau parean duen *Etxanoeta* (**Ikus Etxanoeta**) baserriarekin lotuta agertzen da. Nahiz eta egun eraikin autonomoak izan, badirudi hasiera batean familia berarenak izango zirela. Baliteke aurrean aurkitzen zen eraikina osagarria izatea, eta arnaga moduan funtzionatu izana. Gerora, agian, ezkerreko aldean bizitzeko zatia egin omen zen. Dena den, auzotarren artean *Étxenuétak* moduan izendatzen dituzte etxe bi horiek.

Egitura bitxia daukan baserri etxea da, eta zatika eginda dagoela dirudi, ez baitu batasunik. Hala ere, deigarriena fatxadaren ezkerraldean daukan arku barrokoa da, inguruan hainbatek duenaren modukoa, eta gainetiko leihoak. Sarri gertatzen den bezala, harlangaitza baliatu zuten hormetan, eta harlandua, arku eta leihoetarako.

toponimia

*Izenaren esanahia argia da,* Etxanoeta *baserriaren aurrean dagoen etxea baita.*



# Flores

etxebizitza

Aldaerak: Ploitx
Ahozkoa: Plóidx / Plóitx / Próitx

*"... la casería rústica titulada Flores... situada en la cofradía o barriada de Murgoitio jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende con inclusión del horno ochenta y cinco estados cuadrados de planta solar, y la que se compone de piso bajo con su zaguan, cocina, dos cuartos y cuadras, y de piso segundo con su sala y pajar..."*
*DJE 1/112 or. (1864)*



*43° 9' 27"* *2° 34' 17"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*Uriberrekatik Martilar* aldera kokatzen den eremu aldapatsuan aurkitzen zen jatorrizko *Flores* baserria, eta haren gaineko aipuak XVIII. mendean kokatzen ditugu. Izen bitxia eta forma desberdinak izateko aukera asko eman ez duena. Bizkaiko su-erroldetatik abiatuta (1704, 1745 eta 1796) eta 1967ko udal erroldara bitartean *Flores* izena aurkitzen dugu. Berriztarren artean, dokumentatutako izena erabiltzen da, eta *Plóidx, Plóitx* edo *Próitx* ahoskatzen dute.

Etxe berria, baina XIX. mende amaierako eta XX. mende hasierako tradizioan oinarrituta jaso zutena. Gorputz nagusian bi balkoi lotzen dituen burdineria batek hartzen du protagonismoa, beheko pisuko hiru leihoak babestuz moduan. Atzeratuta dauka beste gorputz bat, balkoiduna hau ere eta ondoko aterpea sortzen duena. Harlandua erabili zuten kantoietan, harlangaitza, hormetan eta egurra, bao guztietan.

toponimia

*Deituretako bat dugu* Flores. *Ez dakigu zein den jatorria, baina oso zabalduta dago Euskal Herrian. Sakanan (Nafarroan), esaterako, oso deitura arrunta da gaur egun. Aitzitik, ez hor bakarrik, 1704an* Flores *izeneko etxe bat baitzegoen Berriatuan, eta 1798an* Floresena *izeneko beste bat Getxon.*




# Gomendio Baserriak

Jatorrizko *Gomendio* (**Ikus Gomendio**) baserria izan zen hasierako etxea, eta, geroago, beste bost eraiki ziren: *Gomendioetxebarri* (**Ikus Gomendioetxebarri**), *Gomendiourrutia* (**Ikus Gomendiourrutia**), *Gomendiourigoen* (**Ikus Gomendiourigoen**), *Gomendiouriarte* (**Ikus Gomendiouriarte**) eta *Gomendioizagirre* (**Ikus Gomendioizagirre).**

## toponimia

*J. Garate euskaltzainak* gomendio *(gaztelaniazko* encomienda*) hitz arruntarekin lotu bazuen ere, guk beste etimo bat ikusten dugu izen berezi horren atzean. Inguruan badira* -io *amaiera duten beste izen asko. Batzuetan, hasierako osagaia ulergarria denean,* Elorrio *izena kasu (*elorri *zuhaixka), lekua adierazi nahi zuela uste izan da; baina, sarritan, badirudi pertsona-izen baten aurrean gaudela, eta hori da, esaterako,* Otxandio *eta* Zeberio *herri-izenen kasua, antzina* Ochandiano *eta* Ceberiano *moduan ageri direnak. Hortaz, pentsa genezake hemen ere* Gomendiano *moduko zerbait izan zela lehen; baina herri-izena ez denez izan, aldaera hori ez dugu bildu. Hortaz, pentsa genezake* Comentus *edo antzeko izenen bat zuen baten jabetzakoa izan zela hau aspaldian. Gogoratu behar dugu 1300an* Ochandio *deitzen zela geroago* Ochandiano *hiria izango zen lekua.*

*Bizkaian, ohikoa da baserriak multzotan agertzea, eta auzunearen izenaz hornituta. Horrela,* Gomendio *inguruan aurkitzen diren baserriak izen konposatuak izango dituzte:*

- **Gomendioetxebarria** *baserri-izena, Gomendio eta Etxebarria toponimoez dago osatuta, eta etxe hori berriena izan zela adierazten digu.*
- **Gomendioizagirre** *baserri-izena Gomendio eta Izagirre toponimoez osatuta dago, azken hori haize eta agirre hitzen arteko lotura delarik. 'Agirre' oso izen arrunta da, eta "agerian dagoena" esan nahi du.*
- **Gomendiouriarte** *baserri-izena Gomendio eta Uriarte toponimoez osatuta dago. Bigarren izenaren osagaiak bi dira: 'uri' eta 'arte'. Uri hitzak "hiri" esan nahi du, baina kasu honetan "auzo" adierarekin aurkitzen dugu eta 'arte' hitzak auzoaren erdiko etxea dela adierazten du.*
- **Gomendiourigoen** *baserri-izena Gomendio eta Urigoen toponimoez osatuta dago. Etxe honek duen bigarren izenaren osagaiak dira:, uri hitza, batuaz "hiri" esan nahi duena, eta -guen atzizkia ("leku gorenean dagoena"), azken hori gero amaiera -goen bihurtu den arren. 'Uri' hitza toponimian ageri denean, sarritan "etxe" esan nahi du, eta adiera oso zaharra da hori. Beraz, "Gomendio auzoko lekurik gorenean dagoen etxea" esan nahiko luke izenak.*
- **Gomendiourrutia** *baserri-izena Gomendio eta Urrutia toponimoez osatuta dago. Bigarren izenaren osagaiak dira 'urruti' hitza ("beste aldean") eta artikulua. Horrela, toponimoak honako hau adierazten du: "beste aldean dagoen Gomendio auzoko etxea".*



# Gomendio etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Koméndidxo / Komúntidxo

*"... una casería denominada Gomendio mayor, sita en el barrio de Murgoitio... radicante en jurisdicción de Berriz... cuya casa se compone de una vivienda, piso llano, principal y camarote, y mide su planta solar tres áreas cuarenta y dos centiáreas y cuarenta y cinco decímetros, equivalentes a noventa estados y cinco céntimos..."*
*DJE 6/243 or. (1896)*



*43° 9' 50"* *2° 34' 24"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Topatutako lehen arrasto dokumentala, hots, *Gomendio*, 1704koa da. Bertan, Murgoitio kofradiaren baitan agertzen den baserri bati erreferentzia egiteko erabiltzen da izen hori. Mitxelenak bere lanean jasotzen du 1100. urtean jada baserri honen berri zutela.

Etxean bi alde bereizten dira: nagusia, jatorrizkoa izango zena, eta bestea, erripa aprobetxatuz ezkerraldean erantsi ziotena, upategia egiteko XIX. mende hasieran. Orduan, teilatua ere altxatu zioten, gailurra lekuz aldatu, eta, itxuraz behintzat, batasuna eman fatxadari. Ate berria zabaldu zuten beheragoko sotoan, harrizko ateburu batekin, eta baita leihoa ere, etxe zaharraren parean. Azken hori eraikin dotorea eta barrokoa da, beste baserri batzuen traza berekoa. Sarrerako arku handiak, gaineko bi leihoek eta batik bat Gomendiotarren armarri dotoreak erdialdeko gorputza nabarmentzen zuten. Aldamenetan, ohiko leiho handia dugu beheko solairuan, eta txikiago bat, aldiz, goikoan. Harlangaitzaz eraiki zuten etxea, eta harlandua erabili zuten, gehienetan legez, arku eta leiho ertzak egiteko. Bestalde, bereizi gura genuke armarria elizgizon bati dagokiola, haren kapelak eta borlek ondo adierazten duten moduan. Baliteke, beraz, Juan Bautista de Zuaza eta Gomendio (1633-1679) Salamancako Unibertsitateko Kanonetako katedraduna izatea sustatzailea.

# Gomendioetxebarria (-a) etxebizitza

Aldaerak: Etxebarria
Ahozkoa: Komúntxebarri



*"... la mitad de la casería de Gomendio Echevarria... situada en la barriada de Murgoitio jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende veinte y cuatro estados equivalentes a noventa y un metros cuadrados de planta solar..."*
*DJE 2/143 or. (1866)*

*43° 9' 55"* *2° 34' 22"* *Berriz Irudítan / J.A. Ramos*

Topatutako lehen arrasto dokumentala 1725ekoa da: *Gomendio Echevarria*. Bertan, Murgoitio kofradiaren baitan agertzen den baserri bati erreferentzia egiteko erabiltzen da izen hori. Ordutik aurrera, beti izen horrekin ezagutua izan da, nahiz eta ahoskeran *Komúntxebarri* aldaera hartu. Baserria Elorriora doan errepidearen ezkerraldean kokatuta dago, *Gomendiourigoen* (**Ikus Gomendiourigoen**) baserriaren azpialdean. Jabeek esandakoaren arabera, baserriaren jatorria XVI. mendean kokatu behar da, nahiz eta egungo eraikuntza XIX. mende hasierakoa izan. Lehen, baserria bi bizitzakoa zen, baina 100 urte baino gehiago dira etxe guztia batu zenetik.

XIX. mendeko tankera xumean egindako baserria da, eta bi isurkitako teilatuduna. Oso aldaketa handiak jasan ditu, kontuan hartzen baditugu fatxada nagusian susmatzen diren konponketa, leiho berriak eta eraldaketak. Ongien mantendu den aldea etxe azpira ematen duena da, hark gorde baititu leiho zaharrak. Horiek aurrean izango zituenen antzekoak dira ziurrenik. Antzina omen zituen etxebizitza biak fatxadan ere suma daitezke. Izan ere, bi dira harrizko ateburudun ateak, eta leihoen antolamenduan ere antzeman liteke, ezkerraldean mantendu direnekin. Harlangaitza da nagusi, eta kalitatezko harlandua ere, leihoetan eta ateetan.



# Gomendioizagirre etxebizitza

Aldaerak: Mututu / Etxetxobarria
Ahozkoa: Mutútu



*43° 9' 41"* *2° 34' 20"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Topatutako lehen arrasto dokumentala 1770ekoa da, eta bertan Murgoitio kofradiaren baitan agertzen den baserri bati erreferentzia egiteko erabiltzen da izen hori. Baserria Elorriora doan errepidearen behealdean kokatzen da, *Uriberrekaren* ondoan. Aurrealdeko leihoan inskripzio bat du, eta "1809" urtea ikus daiteke. Egungo etxea eraiki zeneko data izan daiteke hori. Jasotako informazioaren arabera, dirudienez 400 urte atzera egin behar dugu baserri honen jatorria topatzeko. Antza, jatorrizko baserria egungo baserria baino apur bat goraino kokatuta zegoela, eta hura zaharkitua geratu edo jauzi egin zenean, egungoa eraiki zutela errekaren ondoan. Auzokoek baserriari erreferentzia egiteko *Mututu* izena erabiltzen dute, gutxienez XIX. mendearen erdialdetik hona (*Mututua*, 1857). Dirudienez, ezizen hori familiatik dator: sekretuak gordetzeko abilak omen ziren, eta, horregatik, *Mututu* esaten zieten. Denboran zehar mantendu da, eta Berrizko jende guztiak baserria izen horrekin ezagutzen du. *Etxetxobarri* eta *Etxebarri* izenak ere dokumentatuta daude, eta baliteke *Gomendioizagirre* etxe berria egin zenean izen hori hartu izana.

XIX. mende hasierako etxea da, bi isuritako teilatua duena. Zerbait alboratuta dauka sarrerako atartea, arkuduna barik, zurezko dinteldunа. Leihoak urriak dira. Beheko solairuan, bakarra eta nagusian, hiru. Ganbaran, aireztatzeko, bi bao handi eta beste txiki bi. Harlangaitzaz jasoa, baina harlandua erabili zuten ate eta leihoen ertz guztiak egiteko, baita leiho-hegiak ere solairu nagusian. Erdikoak inskripzio bat dauka, oso baliagarria datatu ahal izateko: *1809*.

# Gomendiouriarte *etxebizitza*

Aldaerak: Uriarte
Ahozkoa: Ódxarte



*43° 9' 54"* *2° 34' 24"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*"... la casería denominada Gomendio Uriarte situada en el barrio de Murgoitio...radicante en jurisdicción de la anteiglesia de Berriz... se compone de piso llano principal y camarote, y ocupa una superficie con inclusión del horno de cocer pan dos áreas y treinta y nueve centiáreas equivalentes sesenta y dos estados y ochenta y dos centimos..." DJE 6/248 or. (1896)*

Topatutako lehen arrasto dokumentala 1704koa da: *Gomendio Uriarte* (Bizkaiko su-errolda). Bertan, Murgoitio kofradiaren baitan agertzen den baserri bati erreferentzia egiteko erabiltzen da izen hori. Ordutik aurrera, forma bera aurkitzen dugu, aldaketarik gabe: *Gomendio Uriarte* (1897, DJE, 6/ 248. or) eta *Gomendio-Uriarte* (BUA, 37), 1930eko hamarkadaren amaieran. Berriztarren artean, *Uriarte* moduan ezagutzen dute baserria, Murgoitio kofradiako *Ódxarte* baserria, alegia.

XIX. mendeko baserri apala da, bi isurkitako teilatua duena. Baliatutako materialak ere xumeak izan ziren: harlangaitza leihoetan eta ateburuan eta egurra. Horien antolaketa irregularra da, neurriei dagokienez; baina kokapenari begiratuz gero, guztiz egokitzen zaizkio etxearen egiturari.



# Gomendiourigoen etxebizitza

Aldaerak: Urigoen
Ahozkoa: Uríon

*"... la casería rústica titulada Gomendio Urigüen... situada en el barrio de Gomendio Cofradía de Murgoitio, jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende con su tejabana tres mil y setenta pies cuadrados de planta solar, y la que se compone de piso llano, de piso principal, su desban y pajar, constando de una vivienda con sus correspondientes cuadras, divisiones y habitaciones, siendo su construcción de paredes de cal y canto..."*
*DJE 1/172 or. (1865)*



*43° 9' 51"* *2° 34' 17"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Gomendio etxe multzoan aurkitzen den baserri honen inguruko aipuak XVI. mendean aurkitzen ditugu: *Gomendio Uriguen* (1543, BAHP, A748/32). Bizkaiko su-erroldetan, ordea, modu bitara aurkitzen da, hau da, *Urigen* (1704) eta *Gomendio Vriguen* (1796). Dena den, aldaketa gutxi aurkitzen dugu dokumentuetan, batez ere izenaren bigarren osagaian: *Uriguen* (*Gomendio Uriguen*, 1761, BAHP, A467/32), *Urigoen* (*Gomendio Urigoen*, 1825, PE/1825) eta *Urigüen* (*Gomendio-Urigüen*, 1939, BUA, 37). Auzotarren artean, eta oro har berriztarren artean, *Urigoen* moduan ezagutzen da, ahozko formarik erabiliena *Uríon* izanik.

Baserriak eraldaketa handiak jasan ditu, eta multzo moduko bat osatzen dute atalek. Gaur egun, etxe bilakatu dena XX. mende hasieran egindako berrikuntza baten ondorio da. Etxea handitu egin zuten eta zaharra atzean geratu zen. Neurri batean, behintzat, saiatu ziren Berriz inguruko baserri etxearen tipologiari jarraitzen, arkua eginez eta bao guztiak (ateak zein leihoak) ardatzen inguruan antolatzen.

# Gomendiourrutia (-a) etxebizitza

Aldaerak: Urrutia
Ahozkoa: Komiñúrti



43° 9' 39" 2° 34' 28" Berriz Iruditan / J.A. Ramos

*"... una casería llamada Gomendio-Urrutia... en la barriada o Cofradía de Murgoitio de la anteiglesia de Berriz, es de dos viviendas, la una hacia el Norte, compuesta de piso bajo, de cocina, dos cuartos y cuadra, y el segundo de dos cuartos, camarote y pajar, y la otra hacia el Mediodía la que en el piso bajo tiene cocina y cuadras, y en la que en el de arriba una sala con dos cuartos, camarote y pajar, existe al frente de la casa la arnaga con el horno, y ocupa con la portalada y zaguanes ciento noventa y cuatro estados de planta solar..."*
*DJE 6/143 or. (1895)*

Bi bizitzako baserri honen inguruko lehen arrasto dokumentala 1704. urteko su-erroldan aurkitzen dugu, bertan *Gomendio Urruti* izenarekin Murgoitio kofradiako baserri bat agertzen baita. Ordutik aurrera, errolda guztietan izango dugu baserri honen berri. Auzokoen artean, *Komiñúrti* da erabilitako izena *Martilarren* magalean kokatzen den baserri honi erreferentzia egiteko. Baserritik *Gomendio* multzoko baserri guztiak bistaratzen dira. Aurrealdean, bi eraikin agertzen dira: biltegia eta *Etxeaurrekogaraie* moduan ezagutzen dena.

Baserri-etxe handia da, bi isurkitako teilatuarekin, eta eraldaketa bat baino gehiago jasan ditu. Alboko fatxadetan eta fatxada nagusian argi eta garbi antzeman daiteke hori, zulatutako leiho berrietan, ezkerraldeko zurezko balkoian, lehenengo solairuko balkoiaren hegalean eta alde batean leiho bati dagokion tokian ezarritako armarrian. Oinarrizko tipologia argia da, Barroko garaikoa. Erdialdea nabarmendu gura izan zuten, arku zoragarriaren eta gaineko balkoien bitartez, eta alboetan leihoak jarrita, pisuka antolatuak. Alboan, ezkerretara, beste sarrera bat dauka, harrizko ateburu dotorearekin eta leiho batekin gainean. Harlangaitza erabili bazuten ere, ate-zangoak, ateak, arkua, etxe-kantoiak, leihoak eta balkoi guztiak harlandu ederrez horniturik daude. Atarteko ateburuan dagoen inskripzioak eraikuntzaren balizko data adierazten digu: "*AÑO DE 1791*". Armarriari erreparatzen badiogu, Gomendio Urrutiartar batena dela ikus daiteke eta fatxada nagusia egin ostean zizelkatu zutela, nahiz eta zaharragoa dirudien. Badakigu horrela izan zela, etxearen alboa ez delako oso leku aproposa armarri bat jartzeko. Baliteke, gainera, etxe zaharreko armarria izatea.



# Lebarieta

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa:

*"... la casería rústica titulada Lebarieta... situada en la barriada de Murgoitio jurisdicción de la anteiglesia de Berriz, que comprende con un poco de huerta, y la heredad llamada Echeaurrecosoloa, que es su pertenecido, seiscientos nueve estados equivalentes a dos mil trescientos diez y siete metros cuadrados superficiales de cabida, componiéndose la caseria de una vivienda, con piso bajo y cuadras..."*
*DJE 2/104 or. (1866)*




*BUA / Mapa topografikoa, 1933*

*Uribelebarieta* (**Ikus Uribelebarieta**) baserriaren atzealdean kokatzen zen baserria dugu, egun desagertuta dagoena. *Loitzaterreka* ondoan kokaturik zegoen, hura bota zenean materialak (harriak batez ere) erabili ziren aurreko baserria handitzeko.

toponimia

Lebario *leku-izenetik sortutako toponimoa dugu hau.* Lebario *izenaren atzean, pertsona-izen bat eta* -iano *amaiera daude,* Domendio *izenaren kasuan bezala. Gaur egun* -io *amaiera duten Euskal Herriko leku izen batzuk antzina* -iano *zirela badakigu, esaterako:* Otxandio *eta* Zeberio *herri-izenak antzina* Ochandiano *eta* Ceberiano *ziren. Abadiño bera ere Abadio moduan ageri da 1212ko agerietan. Hortaz, pentsa genezake kasu honetan ere* Lebarioano *antzeko izenen bat edukiko zuela lehen. Kasu honetan,* Lebario *herri-izena ez denez existitzen, ez dugu horren testigantza zaharrik. Bide batez, komeni da gogoratzea* Ochandio *1300ean ageri zela, eta geroago,* Ochandiano *izena eman zitzaiola udalerriari.*

# Loitzate

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Lotxáte / Lótxete



43° 9' 16"   2° 34' 3"   *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*"... la casa llamada Loizate... en la cofradía de Murgoitio de la anteiglesia de Berriz, es de dos viviendas compuestas cada una de cocina, cuartos y cuadras en el piso bajo, y en el principal de cuartos, camarotes y pajares; al frente la casa accesoria ó arnaga y horno, ocupan unidos edificios con los zaguanes y una pequeña huerta tres cientas cuarenta y cinco y medios estados, o sean trece área y doce centiáreas..."*
*DJE 5/81 or. (1882)*

Berriz eta Elorrio arteko mugan kokatzen den baserri honen inguruko lehen arrasto dokumentala 1704koa da, eta harrezkero, izen berarekin ezagutu da, urteak aurrera egin ahala. Baserriak 1905. urtean Bizkaiko Foru Aldundiak antolaturiko abereen lehiaketa bat irabazi zuenaren seinale, sarrera gainean plaka bat dauka. Izkina batean baserria  XVIII. mendearen hasieran eraiki zela esaten duen inskripzioa dugu.

Baserri etxe ederra da, bi isurkitako teilatua duena eta fatxada itxuraldatuta daukana hainbat obra egin direlako, tartean 1898koa, balkoia zabaldu, leihoren bat itxi, berriak ireki eta eskuma aldean handitu egin zutelako, fatxadaren lerroa aldatuta. Baina oraindik ondo antzeman daiteke XVIII. mende hasieran indarrean zegoen tankera, *Arboletanagusian* (**Ikusi Arboletanagusia**) gertatzen den moduan. Hau da, erdiko gorputza indartu gura izan zuten, atarteko arku biekin eta ardatzean, bata bestearen gainean zabaldu zituzten leihoekin, hau da, lehenengo solairukoa, baita alboetan izango zituen beste biak (bat bakarrik kontserbatzen du) eta ganbarako txikitxoa, besteak beste. Alboko gorputzetan, leiho bana izango zuen, beheko plantan, eta lehenengoan, txikiagoa. Harlangaitza erabili zuten ormetan eta harlandu ederra arku eta leiho ertzetan. Inskripzioak argi eta garbi ematen du jatorrizko etxearen berri: *"HIZO ESTA OBRA JOAN DE LOYZATE Y ANA DE AR(R)IA SU MUGER EL AÑO 1705"*.

toponimia

*Izen honen osagaiak "loitza" ("lohi asko dagoen lekua") eta "ate" dira.*



# Loitzatebarria

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Etxégorridxe / Txósna



*43° 9' 17"* *2° 34' 2"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

XX. mende hasierako eraikina da hau, eta dugun lehen erreferentzia 1905ekoa da, Murgoitio aldean dagoen eraikuntza berri bati erreferentzia egiten diona: *Loizate casa nueva* bati izendatzeko modua izanik. 1967ko Udalerroldan, ostera, *Loizateechevarri* moduan agertzen da. Errepidearen kontra eraikitako baserria dugu, *Loitzate* (**Ikus Loitzate**) baserriaren ondoan. Urteetan zehar eta gaur egun arte, fatxadaren kolorearen ondorioz, *Etxégorridxe* moduan ezagutu izan da; baina, 2001. urtean, obrak egin zituzten eta fatxadako harria atera, urteetan etxea identifikatu duen kolorea desagertuz. Eraikinak izandako funtzioak ere beste izen bat eman dio, urteetan taberna egon baita bertan, eta, horregatik, arrunta da oso Murgoitio aldean baserri honi *Txósna* deitzea.

Lau isurkitako teilatua duen etxea dugu, 1900 inguruan herrietako kaleetan ere egiten zirenen estilo berekoa. Fatxadan ondo igartzen dira obraren bi faseak, nahiz eta ahalegindu ziren azkeneko berrikuntza-lanetan batasuna ematen, leihoen antolamenduaren bidez eta baoen ertzetan harria erabiliz. Hala ere, hasierakoaren eskema oso sinplea da: erdian, sarrerako atea eta horren gainean balkoia, eta aldamenetan, leihoak, neurri berekoak denak beheko eta lehenengo solairuan  eta txikiagoak ganbarako ardatzetan.

toponimia

*Izena osatzeko,* Loitzate *toponimoari "berria" adjektiboa erantsi zaio.*

# Murgoitioamandarro etxebizitza

Aldaerak: Murgoitioandikoa / Amandarrona
Ahozkoa: Amándarro / Amándarrona
Murkutidxandikue



*"... la mitad de la casería titulada Murgoitio andicoa... situada en jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende cuarenta y cinco estados equivalentes a ciento setenta y un metros, y la que se compone de piso llano, zaguan, cocina, aposento y cuadras, y de piso alto con camarote y pajar..."*
*DJE 2/128 or. (1866)*

*43° 9' 41"* *2° 33' 40"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Murgoitioko *Done Joanes* (**Ikus Done Joanes**) gainean kokaturik, Elorrio aldeko mugatik gertu dagoen baserri hau historian zehar izen desberdinekin ezagutu izan dugu. 1792. urtean *Amandarro Murgoyttio* (BAHP, A499/33) aurkitzen dugun bitartean, XIX. mendearen lehen erdian *Murgoitio Amandarro* (1816, BAHP, A169/12) izena ematen zaio. Mende horretako bigarren erdian, aldiz, *Murgoitio andicua* (1867, JCR 2908/008) eta *Amandarro* (1868, DJE, 2/154. or.) aurkitzen ditugu. XX. mendean, ahozko erak nagusitu izan dira, eta *Amandarro* moduan ezagutzen da. Auzotarren artean, ahozko transmisioan ere *Amándarro, Amándarrona* eta *Murkutidxandikue* izenak dira erabilienak.

Oso baserri etxe berantiarra, ateburuko eta leihoburuetako hormigoiak ederto frogatzen duen moduan. Hala ere, etxea eta fatxadaren eskema XX. mende hasierakoen berbera da. Beheko solairua, lehena eta ganbara. Atea, erdian; gainean, balkoia; leihoak, alboetan; eta ganbaran ere leihoak, neurri desberdinetakoak teilatuaren formari egokitzeko. Solairurik inportanteenetako hormetan harlandua bistan du; gorenekoan, ostera, luzitu eta zurituta.

*"…ona leprosuak ekarten sittuen, Elorrixoko ospittala isen san au, isen nik eneban esautu e .. senbat urte isengo dien? Ba, bosteun ero seireun ero estaitt senbat isengo dien, saspireun ero estaitt …da gure aittek esateban selan leprosuek or e, ospittala selan isen san…"*

*Visitacion Berrriozabalgoitia.*

toponimia

Murgoitio *leku izenaz eta Elorrioko* Amandarro *deituraz osatutako etxe-izena dugu.*



# Murgoitiobeña

etxebizitza

Aldaerak: Beña / Sanjuangoa
Ahozkoa: Béñekue / Béña

*"... la casería rústica titulada Murgoitioveña... radicante en jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz [Cofradía de Murgoitio], que ocupa una planta solar de noventa y un estados superficiales, y su antusano y demás terreno libre que está frente de la casa, ciento veinte y seis estados, que hacen doscientos diez y siete estados de cabida..."*
*DJE 1/102 or. (1864)*



*43° 9' 42"* *2° 33' 50"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Baserri honen inguruko lehen aipamena 1704koa da: *Murgueytio de Yuso*. *Done Joanes* ermitaren inguruan kokatzen da, eta mendeetan zehar, izenak hainbat aldaera izan ditu, besteak beste: *Murgueytio Veña* 1746ko su-erroldan, *Murgoitio Beña* 1825eko polizia-erroldan, eta *Sanjuangua eta Beña*. XX. mendean zehar, *Beña* izan da erabilitako izena, eta auzotarrek ere horrela ezagutzen dute baserria. Jatorrian, egungo eraikina XX. mende hasieran eraiki zen, jasotako informazioaren arabera, lehenbiziko eraikinaren teilatua etxearen ezkerraldeko soroaren altueran hasten zen, eta, beraz, ardatz-obrak aprobetxatu zituzten baserriari altuera gehiago emateko. Aurrealdean beste etxea dago, *Beña-arnaga* (1865) eta *Beña accesoria* (1910-1967) izenez ezagutu izan dena. Gaur egun, bertakoek *Beñandikue* esaten diote (**Ikus Beñandikoa**).

XIX. mende amaieran edo XX. mende hasieran berreraikitako baserria da, bi isurkitakoa, eta oraindik oso ondo susmatzen zaizkio etxe zaharraren aztarnak. Oinarrian, XVIII. mendean Berriz inguruan zabaldu zen tipologia dugu, *Etxanoeta* (**Ikus Etxanoeta**) etxean antzeman daitekeena, esaterako. Pisu bat gehiago eraiki zutenean, aukera eduki zuten leihoak handitzeko eta erdikoen ordez balkoiak zabaltzeko. Bestalde, fatxada lau ardatzen arabera ordenatzen da: alboetan, bana eta erdian, bina, arkuaren gainean. Nabarmentzekoak dira sarrerako arkuaren kasetoiak eta ertzetako harri koloretsuaren eta horma zuriaren arteko kontraste aparta.

toponimia

*Murgotio auzo-izenaz eta* Beña *toponimoaz osatutako esanahi iluneko leku izena dugu hau. Auzo-izenaren kasuan, agian, lehenengo osagaia* burgu *izan liteke eta bigarrena* goiti*; baina azalpen horrek alde asko uzten ditu argitzeke.* Beña *izenari dagokiola,* Beñaran *dugu Albiztur herrian eta Mitxelenak* behe *hitzarekin lotu zuen. Hori posiblea litzateke etxe hau 1704ko su-erroldetan* Murgueytio de Yuso *("Beheko Murgoitio", alegia) moduan ageri baita. Ahoz erabiltzen den* Sanjuango *izenak ondoko baselizari egiten dio erreferentzia, Done Joanes Bataiatzaileari baitago eskainia.*





## Cofradia de Murgueytio.

1. Casa de Murgueytio de Iuso de Antonia de Uribe, Vive
en èlla, y ès foguera mayor.
1. Casa de Murgueytio de suso, de Pedro de Murgueytio, Vive en èlla
y ès foguera mayor.
1. Casa de Arroyta Jauregui de Martin de Arroyta Jauregui Vive
en èlla, y ès foguera mayor.
1. Casa de Arroyta de Antonia de Villarreal Vive en èlla, y ès foguera mayor.
1. Casa de Arroyta Onaindia de Martin de Arroyta Onaindia
Vive en èlla, y ès foguera mayor.
1. Casa de Loysate de Juan de Loysate Vive en èlla foguera mayor.
1. Casa de Echanoeta de Martin de Yareba de Echanoeta, Vive
en èlla, y ès foguera mayor.
1. Casa de Gomendio Urruti de Juan de Gomendio Urruti, Vive
en èlla, y ès foguera mayor.
1. Casa de Gomendio, de Dn. Pedro de Madariaga Vive en èlla
y ès foguera mayor.
1/2 Casa de Gomendio Echavarria de Pedro de Abaytua Vive en èlla
Pedro de Amocha, y ès foguera menor.
1. Casa de Uriguen de Maria de Uriguen Vive en èlla foguera entera
1/2 Casa de Echechubarria de Domº. de Lurtua Vive en èlla y es media foguera.
1/2 Casa de Solaburu de Domingo de Ybarra, Vive en èlla, y ès media foguera.
1/4 Casa de Echachua esta cayda, y sus tierras andan en renta, quarta
parte de foguera.
1/4 Casa de Zelayeta de Domº. de Zelayeta, Vive en èlla, y es quarta foguera.
1/4 Casa de Zelayeta de yuso de Juan de Uriguen Vive en èlla, y ès quarta foguera.



***Nuévo Nomenclátor***

***Provincia de Vizcaya*** ***Partido judicial de Durango***

***Ayuntamiento de Verriz***

| Nombres de las poblaciones y viviendas | Clase de las mismas | Distancia a la cabeza del Ayuntamiento |
|---|---|---|
| *Arrítegui* | *Casa de labor* | *2,777 metros* |
| *Arróitas* | *Casas de labor* | *4 kilometros* |
| *Boliñáte* | *Casa de labor* | *1,388 metros* |
| *Celayeta* | *Casa de labor* | *1,800 metros* |
| *Echanóeta* | *Casa de labor* | *2,500 metros* |
| *Flóres* | *Casa de labor* | *3 kilometros* |
| *Goméndios* | *Casas de labor* | *2 kilometros* |
| *Lebaita-uríbe* | *Casa de labor* | *2,500 metros* |
| *Loizáte* | *Casa de labor* | *3,700 metros* |
| *Murgoitio-goxeascóa* | *Casa de labor* | *2,260 metros* |
| *Murgoitio-véña* | *Casa de labor* | *2,600 metros* |
| *Mutútua* | *Casa de labor* | *2 kilometros* |
| *San Juan* | *Hermita* | *2,700 metros* |

*BUA / Udal izendegia, 1859.*





# Nikolasena (-a) etxebizitza

Aldaerak: Nikolasena / Gorroñona
Ahozkoa: Nikólasena



*"... la casería rústica titulada Murgoitiogojeascoa, [también conocida por Nicolasena]... situada en jurisdicción de la anteiglesia de Berriz, que comprende ciento dos estados, equivalentes a trescientos ochenta y ocho metros de cabida, y la que se compone de dos viviendas, con piso llano, de zaguan, dos cocinas y dos cuadras, de piso principal con tres cuartos, dos desbanes pequeños y pajar..." DJE 3/47 or. (1872)*

*43° 9' 40" 2° 33' 47" Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Bi bizitzako baserri hau Murgoitio auzoko goialdean kokatzen da, *Murgoitiobeña* eta *Arboleta* baserrien artean. Dugun lehendabiziko erreferentzia XVIII. mende amaierakoa da: 1796ko su-erroldan *Nicolasena* baserria. Ahozkoan ere izen bera mantendu da, hots, *Nikólasena*, eta batzuk *Gorroñona* ere esaten diote, bizitzetako baten jabearen abizena Gorroño baita. Idatzizko dokumentazioan aldiz, ñabardura batzuekin, beti forma bera mantendu da: *Nicolascua* (1857) eta *Nicolasenecoa* (1881).

XX. mendean handitu zuten baserrian bistan dago XVIII. mende akaberan eta XIX mende hasieran Berriz inguruan gorpuztu zen eskema. Pisu bat gehiago daukala onartuta, antz handia dauka bere ordenamenduan *Etxanoeta* (**Ikus Etxanoeta**) edo *Gomendio* (**Ikus Gomendio**) baserriena, baita *Murgoitiobeñarena* (**Ikus Murgoitiobeñarena**), *Matzagabekoa* (**Ikus Matzagabekoa**) eta *Arroitajauregirena* (**Ikus Arroitajauregirena**) ere. Nabarmenena sarrerako arku zabala da, fatxadako harlanduzko elementu bakarra, bestea luzituta eta zurituta baitago. Bestelako bao edo leihoak ohikoak dira: erdiko gorputzean, pisuko, bina; eta alboetan, beste bi.

toponimia

Nikolas *pertsona-izena eta "etxea" esan nahi duen* -ena *amaieraz osatutako toponimoa dugu. Amaiera horren osagaiak jabetza adierazten duen* -en *deklinabidea eta artikulua dira. Azken finean,* "Nikolasen (etxe)a" *esan nahi du. Bizkaian arruntak dira horrelako egitura duten izenak; baina ez dira oso zaharrak edo ez behintzat Nafarroan bezain zaharrak, eta, horregatik, ez dute deiturarik eman. Gehienak XVIII. mendetik aurrera sortu ziren, edo horrela osatutako izena hartu zuten izen zaharraren ordez. Azken hori da kasu honetan gertatu dena, dokumentuetan behin* Murgoitiogojeascoa *("Murgoitio goikoa", alegia) ere ageri da eta.*



# Solaburu

etxebizitza

Aldaerak: Eperrena
Ahozkoa: Soláburu / Epérrena

*"... la casa titulada Solaburu... sita en la cofradía de Murgoitio de la Anteiglesia de Berriz, es de una vivienda compuesta de un piso bajo con su cocina, cuarto y cuadras... de principal con sus cuartos, camarote y pajares,... contiene con inclusión del horno, zaguan y un pequeño campo libre, ochenta y ocho y medio estados o tres áreas y treinta y siete centiáreas..."*
*DJE 4/246 or. (1881)*



*43° 9' 35"* *2° 33' 39"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*Solabururen* tontorpean aurkitzen den baserriak aldaketa gutxi jasan ditu dokumentazioan jasotako izenetan. Bizkaiko su-erroldetan *Solaburu* agertzen zaigu lehenbizikoz (1704 eta 1796), eta inolako aldaketarik gabe dokumentatzen da hurrengo mendeetan ere: *Solaburu* (1881, DJE, 4/ 246. or) eta *Solaburu* (1967, BUA, CE). Berriztarren artean, *Soláburu* eta *Epérrena* formak dira erabilienak ahozko transmisioan.

XVII. mendeko eskemari jarraitzen badio ere, XIX. mendean altxatu ei zuten baserria. Etxe apala eta sinplea da. Hiru gorputzak ondo baino hobeto igartzen dira: albokoetan leiho bana du solairu bakoitzean, baita erdikoan ere. Honetan berezia da atartearen errematea, egurrezkoa, harlanduzko janben gainean. Harlangaitza da nagusi eta leihoetako erremateak egurrezkoak dira, beranduago zabaldutakoetan ezik. Egurrezkoak dira ere teilatuaren hegalari eusteko jarritako besoak.

toponimia

*Ajangizko eta Mendatako herrietan ere, baditugu* Solaburu *izeneko etxeak. Izenaren osagaiak argiak eta gardenak dira: "solo", konposatuetan* sola *bihurtzen dena, eta "buru", toponimian 'gainean' adiera izaten duena. Izen zaharra da, eta garai batean deitura ere izan zen. 1617an Done Joanes elizako erroldetan, Petronilla Solaburu ageri da, eta urtebete beranduago Santuru Solaburu. Azken hori oso interesgarria da euskal izenaz bataiatu zutelako, ohikoa zenaren kontra.*

# Uribelebarieta etxebizitza

Aldaerak: Uribe
Ahozkoa:



*"... la casería denominada Uribe-lebarieta... situada en la cofradía de Murgoitio de la anteiglesia de Berriz, ocupa un área superficial con inclusión del antusano o basurero de treinta y seis estados o un área y treinta y siete centiáreas..." DJE 6/154 or. (1895)*

*43° 9' 32" 2° 34' 11" Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Baserri honen inguruko lehen arrasto dokumentala 1704koa da, urte horretako su-erroldan *Lubarrieta* izena agertzen baita baserri honi erreferentzia egiteko. Argi dago akatsa dela, eta fonetikoki nahiko berdintsua den *Lebarieta* izenarekin nahastu zutela. XVIII. mende amaieran, aldiz, *Uribe Labaita* agertzen zaigu (1779), eta XIX. mendean zehar, guztiz arrunta da *Uribelebarieta* izena aurkitzea. XX. mendean, *Uribe* izena nagusituko da, eta horrela ezagutuko dute Berrizko herritar gehienek.

XX. mende akaberan berriztatu zuten, XIX. mende amaieran jaso zuten etxea. *Beñandikoaren* (**Ikus Beñandikoa**) antz handia du, atea kontrako aldean egon arren. Honetan moduan, erdialdea indartzeko joera argia da, nahiz eta balkoi bakarra eduki lehenengo solairuan. Behekoan, aldamenetan eta ganbaran leihoak ditu, txikitxoenak goiko alboetakoak izanik, ohikoa den eran. Harlangaitza usatu zuten, jatorriz luzitu eta zurituta egongo zena, kantoietan eta leihoen ertzetan izan ezik, oso kalitateko oneko hareharriz egin baitzituzten.

## toponimia

*Badirudi 1799an ageri den etxe-izen honetan* Uribe *toponimoa eta* Lebarieta *deitura ditugula. Nahiz eta Uribe jauregia (***Ikus Uribetxenagusia***) Okangon dagoen, behin baino gehiagotan Murgoitio kofradian kokaturik ageri da, XVIII. mendeko su-erroldetan.*



# Zelaieta

etxebizitza

Aldaerak: Murgoitiozelaieta / Gomendiozelaieta
Ahozkoa: Séleta / Selaiéta

*"... la casa mayor o principal denominada Celayeta... sita en la Cofradía de Murgoitio de la anteiglesia de Berriz es de dos viviendas, compuesta de piso bajo con sus cocinas, un cuarto y cuadras, y de principal, con cuartos, camarotes y pajares; ocupa con inclusión de las tejabanas, horno, zaguanes, una pequeña huerta y un campito contiguos, ciento cuarenta y medio estados o cinco áreas treinta y cuatro centiáreas..."*
*DJE 4/239 or. (1881)*



*43° 9' 50"   2° 34' 6"*   *Berriz Irudian / T. Angoitia*

Bizitza biko baserri honen gaineko lehen aipamenak XVIII. mendeko Bizkaiko su-erroldetan aurkitzen ditugu: *Celayeta* (1704) eta *Celeta* (1796). Inguruan aurkitzen zen beste baserritik (**Ikus Zelaietazpikoa**) bereizteko, *Celaietta Suso* (1807, BAHP, A134/34) izena eman zitzaion XIX. mende hasieran ere. Mende horretan zehar hainbat ageritan agertzen zaigu, izen desberdinekin, hala nola *Gomendio Celayeta* (1830, BAHP, A219/17). Dena den, XX. mendean *Celayeta* (1910, BUA, RU) izena agertzen zaigu batez ere. Auzotarren artean, *Murgoitiozelaieta* eta *Gomendiozelaieta* moduan ezagutzen da, eta ahozkotasunean *Séleta* eta *Selaiéta* erak erabiltzen dira batez ere.

Baserri galanta, isuri biko teilatuduna. Guztiz simetrikoa da eta bi etxebizitzen banaketa zeharo lortua ezker-eskuman. Mendeetako denboraren joana ohikoak zirenak baino pisu bat gehiago jaso ziotelako eta balkoietan ere igartzen da; harrizkoak, lehenengo pisukoak eta egurrezkoa, gainekoa. Nolanahi ere, bi arku dotoreak orijinalak dira eta euren nagusitasuna gaineko balkoiek indartu baino ez dute egiten, eta bigarren pisuko balkoi luzeak bertikaltasuna hausten laguntzen du. Etxearen alboko gorputzetan, bi dira solairu bakoitzean zabaldu zirenak, txikienak izanik ganbarakoak eta bigarren solairuko izkinakoak. Ertzetako harlanduaren koloreak kontraste bizia egiten du hormen zuriarekin. *Gangutia* (**Ikus Gangutia**) (1912) eta *Urretxandikoaren* (**Ikus Urretxandikoa**) antz handia du eta ia berdintsutzat hartuko genituzke hirurak. Beraz, etxea XX. mende hasierakotzat har daiteke.

toponimia

*Toponimo eta etxe-izen arrunta deitura ere bihurtu zena. Osagaiak "zelai" hitz arrunta eta "ugaritasun" edo lekua adierazten duen -eta atzizkia dira: 'Zelaiak' edo 'Zelaia'. Gogoratu behar dugu "zelai" hitzak bi adiera dituela, hau da, "leku laua" eta "belardia". Horren erakusgarri Mexikoko Zelaia hiria dugu: euskaldunek sortu zuten, eta izen hori eman bide zioten leku lauan, zelai batean, alegia, zegoelako.*

# Zelaietazpikoa (-a) etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Selétazar



*Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*Zelaieta* (**Ikus Zelaieta**) inguruan kokatuta zegoen *Celeta Aspicoa* (1796, Bizkaiko su-erroldak) baserriaren gaineko lehen aipamenak XVIII. mendean aurkitzen dira. Goialdean kokatzen zen baserritik bereizteko, -azpikoa osagaia eransten zaio izenari, eta, horrela, *Celayeta-azpicoa* (1865, DJE, 1/144. or.) eta *Celayeta Aspicua* (1905, BUA, 40. or.) bezalako aipamenak agertzen dira ordutik aurrera. Antza, XX. mendearen erdialdean desagertu zen baserria, eta egun, baserri horren harri batzuk besterik ez dira geratzen. Auzotarrei egindako elkarrizketetan, *Selétazar* izena jaso dugu desagertutako baserriari erreferentzia egiteko.

toponimia

*Zelaieta ondoko etxe honek jatorrizko izenari bereizgarri bi gehitu zizkion: agerietan arrunta den "iturri",* Zelaietaiturri *kasu, eta berriagoa den eta kokapenarekin lotuta dagoen "azpikoa". Hala ere, gaur egun hirugarren izen bat hartu du, eta aurrekoaren laburpena den* Zelaietape *izenaz gain,* Zelaietazar *ere esaten zaio.*



# Zubierrementaria (-a) etxebizitza

Aldaerak: Errementaria
Ahozkoa: Errémentai / Errémentaridxe

*"... la casería rústica titulada Zubirrementeria,... situada en la barriada de Murgoitio de la Anteiglesia de Berriz, que comprende con sus huertas, un poco de heredad llamada Echeoste, zaguan y horno cuatrocientos veinte y cuatro estados, equivalentes a mil seiscientos trece metros de cabida, y la que se compone de sus correspondientes pisos divisiones y habitaciones..." DJE 3/36 or. (1871)*



*43° 9' 49"    2° 34' 30"    Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Nahiz eta aurkitu dugun aipamenik zaharrena 1775ekoa izan (*Zubi Rementeria*), badakigu *Zubierrementari* baserria zaharragoa dela, gutxienez XVI. mendeko aztarnak antzematen baitira baserriaren hormetan. Dokumentazioan izen bera mantendu da aldaera gutxirekin: (*Zubierrementeria* eta *Subia errementaria*). Auzokoen artean, aldiz, arrunta izan da oso beste izen batzuekin aipatzea, adibidez: *Errémentai eta Errémentaridxe*.

Baserri etxe handia, isuri biko teilatuduna. Interbentzio handiak izan ditu, fatxada nagusiari egindako begiratu soil batek ondo adierazten duen moduan. Aitatuko genituzke harri desberdinen erabilera, ganbarako balkoiaren hegalaren hormigoia edo ezkerraldeko obrak. XVI. mendeko horma izan daitekeena ere ikus daiteke fatxada nagusiko eskuma aldean, eta etxearen taxuketa XVIII. mendekotzat har genezake oso eskema onartua zelako daukana, hots, erdiko gorputzean arkua, gainean leiho edo balkoiak, eta aldeko gorputzetan, leiho bana, denbora desberdinetan zulatutakoak. Baina pisu nagusiko balkoi buruan dagoen inskripzio batek XIX. mendearen erdialdean egin zen obra baten berri ematen digu eta segurutik balkoia bera zabaltzea eta fatxada berrantolatzea izango da gogorarazten duena, beste esaldi esanguratsu batzuekin batera. Honela dio: *EN CASA DEL QUE JURA NO FALTARA DESVENTURA. EN ESTA NO SE CONSIENTE HABLAR MAL DEL AUSENTE. ESTA OBRA HIZO JUAN VICENTE DE ZENGOTITA VENGOA. AÑO DE 1845.*

toponimia

*Baserri honen izenaren osagai ditugu: "zubi" hitz arrunta, kokapena adierazten duena, eta lanbidea adierazten duen 'errementari' hitza. Horrela, izenak "zubiaren ondoko errementaria" esan nahiko luke. Ahoz, arrunta da lehenengo zatia desagertzea, ez dagoenean nahasteko aukerarik, eta gauza bera gertatzen da Barinagako Errementari etxearekin. Alabaina, zehatz-mehatz zein etxe den jakin behar zenean, izen osoa erabiltzen zen, eta horrela sortu zen Barinagaerrementeria deitura luzea. Errementariek burdina lantzen zuten, tresnak edo erremintak sortzeko, hala nola abereen ferrak (behor eta zaldienak edo idi eta behienak).*




*Akonastegi*
*Antsoaga*
*Arangurenazpikoa*
*Arangurenetxebarria*
*Aransolo*
*Armotxa*
*Asua*
*Asurruti*
*Bekoerrota*
*Bertoita*
*Bertoitagoikoa*
*Done Mikel*
*Eskolak*
*Gibelondo*
*Goialde*
*Goikoerrota*
*Intxurtxu*
*Iturralde*
*Iturritxueta*
*Lekaime Karmeldarrak*
*Maisu Juan*
*Mekolaia*
*Mekolaiaetxebarria*
*Mendibe*
*Mendikoa*
*Olabebengoetxea*
*Olabelarriñaga*
*Olabetxebarria*
*Olabeurigoena*
*Olabezubiaga*
*Olaberreka*
*Olabezubiaurre*
*Olakueta*
*Ortuondoa*
*Ospitalea*
*Ospitaleuarrea*
*Ospitaleondo*
*Presatxu (Ikusi Olakueta auzunea)*
*Sagarminaga*
*Torretxu*
*Ugartezabala*
*Uribetxenagusia*
*Uribealdekoa*
*Uribeganekoa*
*Uribetxea*
*Uribetxebarria*
*Urretxandikoa*
*Urretxazarra*
*Urretxaburu*
*Urretxagana*
*Urtiaga*
*Urtiagaetxebarria*
*Urtiagazelaia*
*Usabel*
*Zabala*
*Zabalandikoa*



# Akonastegi

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa:



*43° 10' 18"* *2° 34' 17"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

XX. mendean eraikitako etxea da, Olabe etxe multzora doan bide ondoan kokaturik.

Eraikin oso luzanga dugu. Lau isurkiko teilatua dauka, eta gailurra fatxada nagusiarekin paraleloan kokatua. Guztiz era simetrikoan antolatuta dauka fatxada, hiru gorputz balitu moduan: erdian atarte zabala du, egurrezko zutikoak eutsitako dintelaren azpian, eta alboetan, ostera, gorputz bana bi neurritako leihoekin, kutsu klasikodun plakekin inguratuta. Etxearen barnea harrizkoa da, harlangaitzezkoa, alegia, eta bestea luzituta ageri da, pertsianen egur ilunak bizituta.

toponimia

*Izena iluna da eta ez dakigu zer esan nahi ote zuen, nahiz eta litekeena izan ondoan kokaturik dagoen* Akonastegi *iturritik izena hartu izana.*



# Antsoaga

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: **Antzúa**

*"... la casa rústica titulada Ansuagagoicoa... de la cofradía de Oca[ango] de la anteiglesia de Berriz... se compone de piso llano con cocina y tres cuartos, cuadra y tejabana de aditamento y de piso superior destinado a camarote y pajar, y mide su planta una superficie de trescientos treinta y tres metros cuadrados... la tejabana o cuadra situada frente de la casa... mide una planta de ciento cuarenta y dos metros cuadrados..."*
*DJE 6/114 or. (1895)*



*43° 10' 5"* *2° 33' 16"* *Berriz Irudit an / T. Angoitia*

Topatutako lehen arrasto dokumentala 1704koa da, eta bertan, Okango kofradiaren baitan agertzen den baserri bati erreferentzia egiteko erabiltzen da izen hau. Bizkaiko suerroldetan *Ansoaga* moduan dokumentatzen da (1704, 1745 eta 1796), eta gerora, batzuetan ahozko forma ere erabilia izan da zenbait idatzitan: *Ansua* (DJE, 1870, 2/ 226. or.). Auzokoen artean, *Antzúa* moduan ezagutzen da baserri hau.

Erabat berritutako baserri-etxea da. Bi isurkiko teilatuaren azpian, simetrikoki antolaturiko fatxada dauka, pisu bitan eta ganbaran banatua. Pisu bietan lau dira baoak: behekoan, hiru leiho eta atea, alde batean kokatuta erdian barik, eta lehenengoan, aldiz, lau leiho. Ganbaran, ostera, bi leiho baino ez da, eta gailurraren azpian, txori-tokiak. Dirudienez, fatxadak luziturik eta pintatuta izango zituen, baina azkeneko berrikuntzan ganbara aldean utzi zuten horrela, behekoan harlangaitza desestalita. Gaur egun, leihoen eta atearen ertz guztiak harlanduz inguratuta ageri dira, dobeladun dintelaren giltzarria azpimarratuz. XIX. mendeko etxea dirudi.

toponimia

*Erdi Aroko izen erabilienetako bat izan* Antso, *erdaraz* Sancho, *besteak beste Nafarroako errege batzuen izena izan zen.* Antso *hau latineko* santius *izenetik sortu bide zen. Bigarren osagaia* -aga *atzizki arrunta da. Ahoz* Antzoa *esaten zaio ohikoa baita bokalen arteko g jatea eta tz erabiltzea, Bizkaian ez baita* ts *ahoskatzen.*

# Arangurenazpikoa etxebizitza

Aldaerak: Okangoaranguren / Berrizaranguren / Kastorrena
Ahozkoa: Aránguren



43° 10' 32" 2° 33' 8" Berriz Iruditan / J.A. Ramos

*"... la casería rústica titulada Aranguren vieja... radicante en el barrio de Ocango de la Anteiglesia de Berriz, que ocupa una planta solar de doscientos setenta y ocho estados, que equivalen a mil cincuenta y siete metros cuadrados, con inclusión de su tejabana, horno y antusanos, y se compone su piso llano de zaguan, dos cocinas, dos aposentos, cuadra y dos tejabanas unidas a la caseria, y su piso principal de sala, dos cuartos, saleta y alcoba, y en el resto dos pajares, siendo su construcción de paredes de mampostería por los cuatros costados, con los revestimentos de las puertas, ventanas, angulos y arcos de piedra labrada... corresponden a esta caseria... las dos accesorias [Arangurenetxebarria y Mendikoa]..."*
*DJE 1/65 or. (1864)*

Baserri honen gaineko lehen arrasto dokumentala 1704koa da. Berriz eta Zaldibarren arteko mugan kokatzen da, *Aranguren* izenez ezagututako zonaldean. Bertakoek Zaldibarko etxeak eta Berrizkoak bereizten dituzte: *Zaldibararanguren* eta *Berrizaranguren*. Aipaturiko baserri hau eta *Arangurenetxebarria* (**Ikus Arangurenetxebarria**) zein *Mendikoa* (**Ikus Mendikoa**) baserriak jabe berdinarenak ziren.

Auzotarrek *Aranguren* edo *Arangurenazpikoa* moduan ezagutzen dute baserria, baita *Kastorrena* moduan ere. Azken izen hori Juanitaren aitonarengatik datorkio: Jose Castor deitzen zen, eta ondorioz, familia eta baserria *Kastorrena* moduan ezagutu dira. Bestalde, idatzizko dokumentuetan, *Aranguren* (1704, AI-EO), *Berriz Aranguren* (1865, DJE, 1/ 116. or.), *Okango Aranguren* (1745, AI-EO) eta *Aranguren vieja* (1864) DJE, 1/ 66. or.)

## toponimia

*Baserri honen izena, beste kasu askotan bezala, baserria baino zaharragoa da, esanahiak argi uzten duen bezala. Izenaren osagaiak* haran, *Euskal Herriako toponimian arrunta den hitza, oso menditsua den gure herrian ugariak baitira haranak, eta* guren *dira. Azken hitz hau Erdi Aroan ageri da "eder" esangurarekin. Beraz* Haraneder *moduan ulertu behar dugu izen hau, baina garai hartako eta egungo edertasuna ezin ditugu parekatu eta pentsatu behar dugu ugaritasuna edo emankortasunaz ari zirela. Sarritan esan dugun legez Bizkaiko etxe izenak Euskal Herriko luzeenak dira. Arrazoia ulertzea erraza da. Maiz, Erdi Aroan etxe bat egon zen inguruan gehiago eraiki ziren eta guztiek gorde zuten jatorrizko izena. Bereizteko bigarren osagaibat hartu zuten:* Zengoitagoitia, Trañajauregia, Gazteluiturri. *Kasu honetan* Aranguren *guneko etxe biren azpikoa da.*






*BUA / Mapa topografikoa, 1933*

moduan agertzen da. Azken izen hori, batez ere 1851tik aurrera ageri zaigu, Arangurengo etxe berria egin eta gero.

Bizitza biko baserri handia da eta, guztiz simetrikoa ez bada ere, bere fatxada nagusiari erreparatu ezkero, ondo antzematen da etxe orekatua egiteko asmoa. Etxearen ardatza markatzen du atarteko bi arkuen arteko pilareak. Eta horren arabera antolatzen dira leiho guztiak, nahiz eta ezkerraldean, beheko solairuan ez dauden. Lehengo solairuan hiru dira alde bakoitzean; ganbaran, bana; eta tartean, izkinan, txikitxo bana. Jatorriz hormak egiteko erabili zen harlangaitza estalita eta pintatuta egongo zen; arkuen, leiho eta kantalak egiteko usatu zuten harlanduaren kolore gorrixkarekin kontraste eginez. Gaur egun lehengo solairutik gora mantentzen dute hasierako itxura hori. Bi isuritako teilatua dauka. XIX. mendean eraikitako baserria dirudi.

# Arangurenetxebarria (-a) etxebizitza

Aldaerak: Arangurenandikoa / Etxebarria
Ahozkoa:



43° 10' 33"   2° 33' 8"   Berriz Iruditan / J.A. Ramos

*"... la casa accesoria nueva... situada en el mismo barrio de Ocango de la Anteiglesia de Berriz, que ocupa una planta solar de ciento veinte y medio estados, o cuatrocientos cincuenta y ocho metros... y se compone su piso llano de zaguan, cocina, aposento y cuadras, y su piso principal de sala, tres cuartos, tres alcobas y pajar, y en el resto desban, siendo su construccion de paredes de cal y canto por los cuatro costados, y los angulos de piedra silleria, estando construida con bastante solidez..."*
*DJE 1/65 or. (1864)*

Topatutako lehen arrasto dokumentala 1851koa da, eta bertan Okango kofradiaren baitan agertzen den baserri bati erreferentzia egiteko erabiltzen da izen hau. Hortik aurrera, errolda guztietan behin eta berriz agertzen da.

Baserri neoklasiko aparta dugu, XIX. mendean nagusitu zen goranzko tendentzia nabarmena duena. Fatxada nagusia lau ardatzetan antolatu zuten, nahiz eta indargune bikoitza ezartzeko ahalegina egin, batez ere harriz eta burdinsarez hornitutako lehenengo solairuko balkoiarekin. Izan ere, fatxadako harlanduzko horma-zati bakarra bertan dago, eta informazio-plaka ere bai. Beste bao guztiak leihoak dira; txikienak ganbarakoak dira, eta teilatuaren okerdurari egokitzen zaizkio.

Azpimarratzekoa da atartea, izkina batean kokatua, arku beheratu baten babesean. Aipatzekoa da komuna ere, iparraldera ematen duen fatxadan kokatua, balkoiaren antzerako harrizko mentsulen gainean. Sasoiko modari jarraituz, hormak luzituta eta margotuta zeuzkan, harlandua erabiltzen zutelako etxearen kantalak eta baoen ertzak egiteko eta hormetako puntu zehatzak indartzeko. Arestian esan moduan, inskripzio bat dauka, eta honela dio: *"Á ESPENSAS DE / D. FRANCO DE MARQUINA / Y / D.A Y M.A DE GARITA-CELAYA / CONSORTES. / AÑO 1851"*.

## toponimia

*Arestian aipatu dugun moduan (***Ikus Arangurenazpikoa***)* Haraneder *moduan ulertu behar dugu izen hau, baina garai hartako eta egungo edertasuna ezin ditugu parekatu eta pentsatu behar dugu ugaritasuna edo emankortasunaz ari zirela. Kasu honetan izenaren bigarren osagaiak erakusten digu* Aranguren *guneko etxe berriena izan zela.*



***Nuévo Nomenclátor***

***Provincia de Vizcaya*** ***Partido judicial de Durango***

***Ayuntamiento de Verriz***

| **Nombres de las poblaciones y viviendas** | **Clase de las mismas** | **Distancia a la cabeza del Ayuntamiento** |
|---|---|---|
| *Ansúaga* | *Casa de labor* | *2,777 metros* |
| *Arangúren* | *Casa de labor* | *3 kilometros* |
| *Aranzólo* | *Casa de labor* | *1,850 metros* |
| *Armócha* | *Casa de labor* | *2,800 metros* |
| *Ásua* | *Casa de labor* | *2,777 metros* |
| *Asurrútia* | *Casa de labor* | *2,800 metros* |
| *Becoerróta* | *Molino* | *2,500 metros* |
| *Bertóita* | *Casa de labor* | *2,700 metros* |
| *Yturralde* | *Casa de labor* | *2 kilometros* |
| *Mecoláya* | *Casa de labor* | *2 kilometros* |
| *Mendíbe* | *Casa de labor* | *2,770 metros* |
| *Mendicóa* | *Casa de labor* | *4 kilometros* |
| *Olábe* | *Caserio* | *750 metros* |
| *Olacuéta* | *Caserio con su Hermita* | *500 metros* |
| *Sagarmínaga* | *Casa de labor* | *2,777 metros* |
| *San Miguel* | *Hermita* | *2,500 metros* |
| *Ugárte-Zabála* | *Casa de labor* | *1,800 metros* |
| *Uríbes* | *Casa y molino* | *2 kilometros* |
| *Uribe-echéa* | *Casa de labor* | *1,860 metros* |
| *Uribe-ganecóa* | *Casa de labor* | *1,850 metros* |
| *Urréchas* | *Casas de labor* | *640 metros* |
| *Urtiágas* | *Casas de labor* | *2 kilometros* |
| *Zabálas* | *Casas de labor* | *1,830 metros* |

*BUA / Udal izendegia, 1859.*





# Aransolo

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: **Aránsolo**



43° 10' 19"     2° 33' 39"     *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*"... la casería rústica titulada Aransolo... radicante en la Cofradía de Ocango, jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende con su zaguan y tejabana adherentes un solar de sesenta y tres estados, y la que se compone de una habitación y un piso alto..."*
*DJE 1/78 or. (1864)*

Topatutako lehen arrasto dokumentala 1704koa da, eta bertan Okango kofradiaren baitan agertzen den baserri bati erreferentzia egiteko erabiltzen da izen hau, hots, *Aransolo* (Bizkaiko su-erroldak). Hortik aurrera, errolda guztietan behin eta berriz agertzen den baserria da, eta izenari dagokionez, ia aldaketarik ez du jasan hiru mende hauetan: *Aranzólo* (1859, BUA, Nmcr) edota *Aransolo* (1967 BUA, CE). Auzotarrek *Aránsolo* forma erabiltzen dute ahozko komunikazioan.

Izugarrizko berrikuntza eta handitze lanak egin berri dizkioten baserria da, ganbara aldeko solairua jaso arte, hormigoia erabiliz. Lehen ere izan zituen hainbat eraldatze, leiho bateko XVIII. mendeko inskripzioak adierazi moduan. Lau isuritako teilatua bazeukan ere, orain bikoa du eta itsatsita beste etxe berri bat egin diote. Dena den, harlangaitzaz egindako etxe handia da, ohiko kalitateko harlanduekin kantaletan, leihoetan eta osteko ate baten dobeladun dintelean, nahiz eta badituen egurrezko dinteldun baoak ere.

toponimia

*Hain menditsua den gure Euskal Herrian oso arrunta da* haran *hitzaz osatutako leku-izenak. Bigarren osagaia* solo *da eta gaur egun baratza moduan ulertzen bada ere,* ortua *edo* baratza *eta* soloa *ez dira gauza bera izan. Soloan garia, eta geroago artoa eta patata, ereiten ziren eta baratzean, berriz, lapikokoak. Gure kasu honetan* haraneko soloa *hau garai batean deigarria izan behar zen etxe baten izena bihurtzeko. Agian XVI. mende arte ohikoa zelako garia maldetan ereitea ibarrak hezeegiak zirelako.*



# Armotxa

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: **Ármotxa**

*"... la casería rústica titulada Armocha... situada en el barrio de Ocango jurisdiccion de la Anteiglesia de Berriz, que ocupa una planta solar de ochenta y dos y medio estados cuadrados superficiales, y la que se compone en su piso llano de cocina, un aposento, horno cortijo y cuatro cuadras, y de piso principal con tres cuartos y dos pajares, y sobre estos dos desbanes, siendo su construccion de paredes de mamposteria..."*
*DJE 1/116 or. (1864)*



*43° 10' 26"* *2° 33' 19"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*Armotxa* tontor ondoan kokaturiko baserrietxea Bizkaiko su-erroldetan agertzen zaigu lehenengoz 1704. urtean, *Armocha*. Hortik aurrera, errolda guztietan behin eta berriz agertzen bada ere, aldaketarik ez du jasan: 1859ko izendegian zein 1967ko erroldan, *Armocha* aurkitzen dugu. Okango aldeko berriztarrek *Ármotxa* forma erabiltzen dute baserriari eta hura kokatzen den tontorrari men egiteko.

XIX. mendeko baserria da, apal samarra, bao guztiak egurrezko dintelak baitituzte. Behin baino gehiagotan ikusi dugun eskemaren arabera antolatu zuten: baoak hiru ardatz bertikaletan jarrita, hiru solairuetan. Beheko pisuan, ezkerraldean, atartea dauka, eta ondoan, leiho bi. Lehenengo solairuaren erdian, balkoia dago, eta aldamenetan, aldiz, leiho bana. Ganbaran, azkenik, hiru leihotxo ikus ditzakegu, behekoekin lerrokatuta. Hormetarako harlangaitza baliatu zuten, eta kantaletan, berriz, harlandua. Teilatua bi isurkikoa du.

toponimia

*Badirudi izen honetan dugun lehenengo osagaia,* ar-, *oso arrunta den* harri *dela, baina bigarrena zer den ez dakigu.* Armotxa *izeneko lekuak daude Bilbon eta Aramaion.*





# Asua

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Asúa / Asúe



43° 10' 9" 2° 33' 25" Berriz Iruditan / J.A. Ramos

*"... la casería rústica titulada Asua... radicante en jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz... comprende en el recinto que ocupan sus paredes ciento treinta estados, equivalentes a cuatrocientos noventa y cuatro metros quinientos veinte milímetros de cabida, y la que se compone de sus correspondientes cuadras divisiones y habitaciones..." DJE 2/230 or. (1870)*

Arestian aipatutako baserriekin bezala, Okango kofradian kokatzen den baserri honen izenak (*Asua*) aldaketa gutxi jasan ditu XVIII. mendetik hona. Bizkaiko su-erroldetan *Asua* (1704, 1745 eta 1796) moduan agertzen da, eta 1967ko erroldan ere, berdin idatzita aurkitzen dugu. Tartean, batzuetan *Azua* (1865, DJE, 1/148. or.) topatzen badugu ere. Auzotarrek, eta, oro har, berriztarrek As*ú*a edo *Asúe* formak erabiltzen dituzte euren arteko berbaldietan.

Baserri etxe handia, XVII. mendean hedatu zen egituran jasoa, nahiz eta hurrengo mendekoa izan daitekeen. Hori pentsarazten du atarteko egurrezko dintelari eusteko daukan koloma klasiko toskanarrak, halakoa baita 1723ko *Isuntzabekoa* (**Ikus Isuntzabekoa**). Ohiko hiru gorputzak bistan ditu, eta azkeneko eraberritzean aldaketa sakona izan du, are gehiago argazki zaharretan agertzen zuen aurri itxuraz konparatzen badugu. Aldameneko bi gorputzak harrizkoak dira eta, gainera, eskuma aldekoa da bi pisuak material horretakoak dituena eta fatxadan ere irtenago agertzen dena. Erdialdean eta ezkerraldean, ostera, egurrezko egitura eta adreilua dira nagusi. Gaur egun, lehenengoan bistan daukan egurrezko egitura guztiz sinplifikatuta dago eta ezkerraldean, gainera, zurajea adreiluek ezkutatu egiten dute. Ganbara aldeko txori-tokiak berriak dira. Teilatua bi isuritakoa da.

toponimia

Asua *izeneko toponimoa arrunta da Euskal Herrian eta, esaterako Erandioko leku ezaguna dugu. Mitxelenaren ustez etimoa* harri + zu *izan daiteke eta "leku harritsua" esan nahiko luke. Amaieran, nola ez, artikulua dugu eta* Asuko, Asutik,... *esaten da.*



# Asurruti

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Ásurti



43° 10' 9" 2° 33' 19" Berriz Iruditan / J.A. Ramos

*Asua* (**Ikus Asua**) baserriaren parean kokaturiko *Asurruti* baserri-izenak aldaera ugari izan ditu azken mendeotan. XVIII. mendeko Bizkaiko su-erroldetan, adibidez, hiru izen desberdin jasotzen dira: *Asu Urruti* (1704), *Asurruti* (1745) eta *Asu Vrrutia* (1796). Hortik aurrera, *Asurruti* forma nagusitzen da, dena batera idatzita: *Asurrutia* 1825eko polizia-erroldan eta *Asurrutia*, aldiz, XX. mende hasierako udal-dokumentazioan.

Dena den, 1857ko eraikin-erroldan bananduta aurkitzen dugu: *Azua-urrutia* (BUA, Viv). Baserri honen izendapena gertu duen *Asua* baserriarekin lotuta dagoela nabaria da. Ahozkotasunean, *Ásurti* forma da erabiliena auzotarren artean, eta horren harira, uste dugu jabego-erregistroan jasotzen diren *Asurti* (1870, DJE, 2/ 225. or.) eta *Azurti* (1892, DJE, 6/ 114. or.) erak ahozkotasunetik eratorriak direla, hots, jabeak erregistratu zuenean erregistratzaileak entzun bezala jaso zuen.

Baserri etxe handia, bizitza bikoa, zeharo eraberritu dutena jatorrizko itxura desagertu arte. Gaur egungo eredua XVII. mendean hedatu zena da, hau da, hiru gorpuzduna. Erdian, atartea dugu, egurrezko zutikoak eutsia eta, al-

toponimia

Asua *etimoaz esandakoaz aparte (***Ikusi Asua***) kasu honetan urruti hitzak gaur egun leku urrun batean dagoela esan nahi du, baina lehenago "beste aldekoa" adiera zuen. Bilbon, esaterako* Urazurrutia *dugu, "ibaiaren beste aldean".*






*Berriz Iruditan / T. Angoitia*

damenetan, gorputz trinkoak. Honetan erabilitako materiala harria da, beheko solairuan, eta gainerakoetan, luzituta dago harlandua kantaletarako utziz. Erdikoan ostera, egurrezko egitura adreiluekin osatzen da. Bi isuriko teilatuduna da eta, erdikoa bikoitza den arren bizitza bien artean banatzeko, ez da simetrikoa, ezkerraldea zabalagoa delako. Baoei dagokienez, beheko plantan leihoak dauzka, balkoiak lehenengoan, eta leiho txiki bana, ganbaran. Baina honen aurretik zegoen baserri zaharra Berrizko interesgarrienetarikoa zen. Goitik beherainoko egurrezko egitura zeukan eta adreilua zen hormak betetzeko erabilitako material nagusia. Harlanduzko kantalak eta halako leihoa zituena ezkerraldekoa zen. Beste aldean, berriz, egurrezko egitura lurreraino heltzen zen, izugarrizko tantaiekin. Beheko solairuko bitarteak harlangaitzaz beteta zeuden eta gaineko guztia, lehenengo solairua eta ganbara ere, adreiluzko hormekin atonduta. Oraingoak gorde du aurretik zegoenaren asimetria, baina ez, ostera, atarteko dintelari eusteko zeukan koloma klasikoa, ezta baoen antolamendua eta teilatuaren hegalari eusteko besoak ere.

# Bekoerrota etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Bekórrota



*43° 9' 57"* *2° 33' 39"* *Berriz Iruditan / K. Amezua*

*"... la casería rústica titulada Molino de abajo... radicante en jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende con lo que ocupa el edificio y sus antusanos ciento treinta y seis estados poco más o menos, equivalentes a quinientos diez y siete metros trescientos cuarenta y cuatro milímetros de cabida... y se compone de su maquinaria, cuadras, pisos, divisiones y habitaciones..."*
*DJE 3/2 or. (1870)*

*Uribe* aldean *Zaldua* errekaren urak aprobetxatzen zituen beheko errota da honako hau. XIX. mendearen erdialdean topatzen ditugu lehen aipu dokumentalak: *Becoerrota* (1857, BUA, Viv) eta *Becoerróta* (1859, BUA, Nmcr). 1870. urtean jabego-eskrituretan gaztelaniazko era topatzen dugu, hots, *Molino de abajo* (1870, DJE, 3/ 2. or.), *Uribe* inguruan aurkitzen den *Goikoerrota* (**Ikus Goikoerrota**) edo *Molino de Arriba* delako errotatik bereizteko. Salbuespen hori kenduta, hortik aurrera forma berdinak aurkitzen ditugu; *Beco Errota* (1905, BUA, 40. or.), *Becoerrota* (1928, BUA, 32. or.) eta *Becorrota* (1967, BUA, CE) dira horren adibide. Auzotarren artean, *Bekórrota* da formarik erabiliena.

Izenak adierazi moduan, errota izandako eraikina da, guztiz eraberritu dutena, aurretik ere hainbat berrikuntza izan ondoren. Azkenekoan entokadura guztia, estilo arrazionalistako balkoiak eta begiratokia kendu dizkiote, baita ezkerraldean zegoen atea ere. Oso interesgarriak dira eskuma aldean desestali den errotaren estoldaren ganga eta antapara. Etxea eta jatorrizko errota bateratuta badaude ere, harriaren kalitateak produkziorako gunea ondo taxututa zegoela argi uzten du. Harlanduzko leiho bi ditu ostean, arkuaren gainean, eta kantalak ere horrelakoak ditu, XVIII. mendeko estiloei jarraituz. Etxea ere harrizkoa da; baina baoek, esaterako, egurrezko dintelak dituzte.

Fatxada nagusiak beranduago jasotakoa dirudi, eta, neurri batean, simetrikotasuna gordetzen du, errota aldea zabalagoa izanik. Indarra erdialdean dauka jarrita, egurrezko dintela duen atartearen gainean. Hor jarri zituzten balkoiak: luzeagoa lehenengo solairuan, eta motzagoa, berriz, ganbaran. Izkinetan, aldiz, leihoak ditu. Bi isurkiko teilatua dauka.

### toponimia

*Izen honen esangurak ez du aparteko azalpenik behar baina interesgarria da* errota *hitzaren historia. Hitza latinetik hartu genuen euskaldunok eta gaztelaniazko* rueda *hitzaren jatorri bera du,* rota*. Hala ere, mendabaldeko Euskal Herrian* bolu *hitza erabili genuen lehenago eta hor dugu* Bolibar*, esaterako. Latinetik hartzea logikoa da erromatarrak heldu aurretik bestelako errotak, eskuz mugitzen zirenak, erabiltzen ziren eta. Erroten kasuan, beste edozein eraikin baino arruntagoa da izen berezirik ez izatea eta errota edo* Goiko, Beheko *eta abar deitzea.*



# Bertoita

etxebizitza

Aldaerak: Bertoitazarra
Ahozkoa: Bertóitte / Bertoitte sárra

*"... la casería de Bertoita y sus pertenecidos radicantes en jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz... situada en la Cofradía de Ocango... ocupa una planta de setenta y cinco estados superficiales que equivalen a doscientos ochenta y cinco metros cuadrados y se compone con su piso llano de zaguan, dos cuadras, una de ellas pequeña, cocina y cuarto, en el piso principal dos cuartos y en el resto desban y pajar. Todas las obras de esta casa se hallan en estado regular..."*
*DJE 3/223 or. (1877)*



*43° 10' 15"* *2° 33' 29"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Baserri honen gaineko lehen arrasto dokumentala 1704koa da, eta bertan Okango kofradiaren baitan agertzen den baserri bati erreferentzia egiteko erabiltzen da izena. Baserriaren izenari dagokionez, aldaketa gutxi jasan ditu. Beti *Bertoita* formarekin ezagutu izan da, eta ahozko transmisioan ere horrela mantendu izan da, *Bertóitte*. Zenbait idatzitan behin baino gehiagotan *Bertoitas* moduan jaso dira zonalde honetan eraikitako etxebizitza bi hauek; baina, izatez, bata *Bertoita* da, eta bestea *Bertoitagoikoa*. Azken hori XX. mendearen erdialdean erre eta berreraikia izan zen beste soro batean (**Ikus Bertoitagoikoa**).

Aldaketa handiak jasan dituen baserri etxea da, gaur egun hiru bizitzakoa dena, lehen bikoa bazen ere. Bi bolumenez osatuta dago, ikusi batean argi frogatu legez eta arretaz erreparatu ezkero, aspaldiko baserri zaharraren atarte erdia soma daiteke eskumako etxearen izkina batean. Izan ere, egurrezko dintelari eusten zion zutikoak han dirau oraindik. Beste guztia berriagoa da. Eskumako etxea XIX. mende amaierakoa da, bi solairutakoa eta ganbaraduna, lau ardatzetako baoen antolamendua daukana, egurrezko dinteldunak hain zuzen. Atarte gaina du indartua balkoiaren bitartez. Lau isuritako teilatuaren azpiko etxeak hormak margotuta ditu eta harlandua kantaletan baino ez dauka. Ezkerraldekoak ere ertzak horrelakoak ditu, baina XX. mende akaberan eraberritu zuten, bitan banatuz. Batak fatxada luzitua du, ondokoaren estiloan, egurrezko dinteldun baoekin eta lehenengo solairuan, simetriko antzean, balkoi itxia dauka. Ganbaran, balkoi sakona eta leihoak teilatuaren kontra. Besteak, berriz, harria du fatxadako protagonista, ganbaran adreilua nahiago izan arren. Baoen antolaketa bestearen oso antzekoa da, baina burdinsarezko balkoia dauka eta ganbaran, balkoiaren ordez, begiratoki arkuduna. Aldatsa aprobetxatuz, biek daukate sotoa, XVI. mendean upategia zena.

toponimia

*Koldo Mitxelenak idatzi zuen holako izenetan ageri den* -ita *amaieraren atzean* -ieta *egon litekeela baina ez zuen segurtasunik eta maisuak ez bazuen guk are gutxiago. Berrizen bada bat baino gehiago* Besoita *edo* Arroita*, esaterako. Gure kasu honetan germanar jatorriko* Bertus *izena egon liteke pentsa genezake.*



# Bertoitagoikoa (-a) etxebizitza

Aldaerak: Bertoitaetxebarria
Ahozkoa: Bertóitte



43° 10' 18" 2° 33' 29" Berriz Iruditan / J.A. Ramos

*"... la casa rústica titulada accesoria de Bertoita... radicante en el barrio de Ocango de la Anteiglesia de Berriz, que ocupa una planta solar de ciento cuarenta y medio estados, o quinientos treinta y cuatro metros, incluso los antusanos y huertecita contigua, y se compone su piso llano de tejabana, cocina y un cuarto, y su piso principal de dos cuartos, desban y pajar, siendo su construcción de paredes de mampostería por los cuatros costados..."*
*DJE 1/70 or. (1864)*

Jatorrizko *Bertoita* (**Ikus Bertoita**) baserriaren eraikin gehigarria zena: *Bertoita arnaga* (1869, DJE, 2/ 200. or.). Gerora bizitza izatera pasatu zen, eta, horregatik, etxe hau ere beti *Bertoita* izenez ezagutu izan da. Zenbait idatzitan, behin baino gehiagotan *Bertoitas* moduan jaso izan dira eremu honetan eraikitako etxebizitza bi hauek.

Bertakoek, bata eta bestea bereizteko, *Bertoita* eta *Bertoitagoikoa* moduan izendatzen dituzte, gutxienez azken bi mendeetan. Azken hori XX. mendearen erdialdean erre, eta berreraikia izan zen, bidearen goiko aldean. Hortik datorkio *Bertoitaetxebarria* izena ere hartu izana zenbaitetan; 1967ko Udal-erroldan, adibidez, *Bertoitabarri* ageri zaigu.

Lehen aipatu dugun moduan, hau ere auzotarren artean *Bertóitte* izenez ezaguna izan da, inongo bereizketarik egin gabe.

XIX. mendean zabaldu zen estiloan egindako baserri-etxea dugu. Harrizkoa da, eta harlandua kantaletan eta erdian dagoen atartearen janbetan bakarrik erabili zuten, dintela egurrezkoa baita. Baoen beste dintel guztiak ere egurrezkoak dira, gaur egun dobelak imitatuz pintatuta ageri badira ere. Bestalde, fatxada oso modu sinplean antolatu zuten, hiru ardatzen arabera. Bereziena, atartearen gaineko balkoia da, eta ganbara aldean, horma luzituta eta margotuta izatea, bi leihok zulatua. Teilatua bi isurkikoa dauka.

toponimia

Bertoita *izenaz osatutako etxe izena. Esan dugun legez Bizkaian ohikoa da etxe izenetan auzoaren edo zaharragoa zen beste baten izena agertzea eta horregatik Bizkaiko deiturak dira Euskal Herrian luzeenak gure deiturak etxe izenetatik sortu baitziren. Kasu honetan izenaren bigarren osagaiak kokapenari erreferentzia egiten dio.*



# Eskolak

etxebizitza

Aldaerak: Uribe eskolak
Ahozkoa:



43° 9' 59" 2° 33' 33" Berriz Iruditan / J.A. Ramos

Sarriako *Eskolak* sarreran aipatu dugun moduan, Berrizen Euskal Herriko beste hainbat herrietan bezala, auzo eskolak ere egon ziren, tartean hemen dugun Uribeko *eskola*. *Antxinako Berriz. Bizimodua eta ohiturak* liburuan jasotzen den moduan, XX. mende hasieran honako eskolak zeuden Berrizen: Sarrian, Andikoan (bi), Elizondon (bi), Olakuetan (bi) eta Uriben.

Auzoko eskola izandakoa da, XX. mende hasieran Bizkaiko landa auzo askotan, Diputazioaren eraginpean eta udalen laguntzarekin, jaso ziren horietakoa, euskaraz irakatsi eta analfabetismo tasak jaisteko asmoz. Eraikin sinpleak izaten ziren, gela gutxirekin, ume denak elkarrekin, batera egoten zirelako. Besterik ere egoten zen, sukalde, jantoki edo biltegi moduan erabiltzeko, baita komunak eta su-egurra gordetzeko ere. Inguruan zeuden materialekin eraikitakoak dira, hau da, harria eta egurra. Aterpea ere izaten zuten eskolari atxikita, Uribekoan gertatzen den legez.

toponimia

*Eskola hitzaren ibilbidea oso deigarria da, Grekerazko hitza da eta hasieran "astia" edo "denbora librea" esan nahi zuen. Geroago astia zegoenean, hots lan egiten ez zenean, egiten zuena izendatzeko hasi zen erabiltzen eta azkenean ikasketa denbora izatera pasatu zen. Gero lekua izendatu zuen. Latinaren "erruz" zabaldu zen hitz hau mundu osora. XX. mendearen hasieran, purismo garaian, ikastola hitza hasi zen erabiltzen eta Bizkaiko Foru Aldundiak eraiki zuen auzo-eskoletan Escuelas de Barrio de Vizcaya / Bizkaya'ren Auzo-Ikastola ageri zen. Geroago, berriz, Ikastola hasi zen eskola euskaraz ematen zuen eskola izendatzeko. Ikastola hitza Sabino Aranari zor diogu, baina ez zuen ezerezetik sortu, Larramendik asmatutako ikastola hartu baitzuen.*

# Gibelondo

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Gibelóndo / Gibíllondo



43° 10' 31" 2° 34' 12" *Berriz Irudita n/ J.A. Ramos*

*"...una casería titulada Guibelondo... sita en termino de la anteiglesia de Berriz, compuesta en el piso bajo de cocina y cuadras, y en el alto de tres cuartos, camarote y pajares,... ocupa con inclusión del horno y zaguanes una planta solar de noventa y un estados o tres areas, cuarenta y seis centiareas..."*
*DJE 5/181 or. (1886)*

Olabe auzunean aurkitzen dugun baserri honen gaineko lehen aipamena XVIII. mendeko Bizkaiko azken su-erroldan aurkitzen dugu: *Gibelondo* (1796). Aldaera gutxi ezagutu duen izena da honako hau, eta *Guibelondo* (1857, BUA, Viv) edo *Guibelondo* (1967, BUA, CE) dira horren adibide. Berriztarren artean, *Gibelóndo* edo *Gibíllondo* dira formarik erabilienak.

XIX. mendeko tankeran eraikitako baserria da, berriztatze sakona jasan duena, besteak beste zementuzkoak egin dizkiotelako teilatua eta fatxada nagusiko alderik aldeko balkoia. Luzitutako hormak ere garbitu egin dituzte eta harlangaitza bistara ekarri, baina oso argi ikusten da zein izan zen etxearen antolamendua. Fatxada nagusia zeharo simetrikoa da eta ardatzaren arabera zabaldu ziren bao guztiak. Hala, erdian dinteldun atea dauka eta alde banatan, leiho bana. Lehenengo solairuan, lerrokatuta, leiho luzeak, balkoi bakarrera zabaltzen direnak; eta ganbaran, erdian, leihotxo bat. Denak harlandu ederraz inguratuta.

toponimia

*Inorentzat harrigarria izan daiteke gibela agertzea toponimian, baina euskalki askotan bizirik dago* atze *esangurarekin. Beraz,* Atzeondo *esan nahi du.*



# Goialde

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa:



*43° 10' 9"* *2° 33' 5"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Berriz eta Zaldibar arteko mugan XX. mendearen azken laurdenean eraikitako etxebizitza berria dugu honako hau, *Sagarminaga* (**Ikus Sagarminaga**) baserritik Komentura doan bidearen ondoan kokatzen dena. Haren kokapenari erreparatuta hartu du *Goialde* izena.

Etxe berria, txalet erakoa, bolumen desberdinez osatua, etxebizitza desberdinei egokitzeko. Aldatsa aprobetxatuz jaso zuten eta behealdean, bizilekua badago ere, etxe modernoen instalazioak ere baditu, garajea kasu. Hau barne, bi solairu baino ez ditu, eta sarrera kanpoko eskaileren bitartez egiten da, hormigoizko posteak eutsia. Fatxadetan harria erabili zuten beheko solairuan, harrobiko markadunak kantaletan. Goikoa, berriz, zuri pintatua dauka. Kontrastea pertsiana ilunek eta sarrerako balkoiaren egurrezko karelak areagotzen dute.

toponimia

*Izen gardena bestelako azalpena behar ez duena, kokapenari erreferentzia egiten duen etimoa. Alde osagaia arrunta bada ere ez da etxe izenetan sarri agertzen inguru zabalak izendatzeko erabiltzen delako,* Durangaldea *toponimo ezagunean bezala.*

# Goikoerrota etxebizitza

Aldaerak: Uriberrota
Ahozkoa:



43° 9' 59" 2° 33' 29" Berriz Iruditan / J.A. Ramos

*"... la casa Molino rustico titulado de arriba, sin que se exprese su numeración, radicante en jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende con lo que ocupa el edificio, cauce y presa, ciento noventa estados poco más o menos, equivalentes a setecientos veinte y dos metros sesenta milímetros de cabida... y se compone de su maquinaria, cuadras, divisiones y habitaciones..."*
*DJE, 2/ 240. or. (1870)*

Okango kofradiaren baitan aurkitzen dugun Uribe auzoan errota bi daude *Zalduerreka* ur emarian: *Bekoerrota* (**Ikus Bekoerrota**) eta *Goikoerrota*. Azken hori izen desberdinekin ezagutu izan da azken mendeetako dokumentazioan. Horrela, 1825eko polizia-erroldan *Molino de Uribe* moduan agertzen den bitartean, urte batzuk geroago *Molino de arriba* (1870, DJE, 2/ 240. or.) moduan agertzen da jabego-eskritura batean. XX. mende hasieran Udal-errolda batean *Urive Molino* (1910, BUA, RU) moduan agertzen da, eta 1967ko erroldan, aldiz, lehendabizikoz euskarazko izena agertzen zaigu, *Goicoerrota* (1967, BUA, CE), hain zuzen ere. Auzotarren artean, *Uribeko errota* edo *Uriberrota* moduan ezagutzen da.

1800. urtearen inguruan eraikitako baserri-errota da. Harlangaitza erabili zuten berau jasotzeko, eta harlandu ederra, aldiz, etxearen kantaletan, leihoetan eta atarteko arkuan eta janbetan. Fatxada nagusia oso modu sinplean eratu zuten, bi isurkiko teilatuaren azpian. Indarra erdialdean jarri zuten, hau da, arkua, gaineko leihoa eta ganbarako txikia. Lehenengo solairuko izkinetan, berriz, leiho bana dauka, eta behean, bakarra, *Belakortu* (**Ikus Belakortu**) baserri errotan gertatu antzera, itsua baita behealde guztia.

## toponimia

*Izen honen esangurak ez du aparteko azalpenik behar baina interesgarria da* errota *hitzaren historia. Hitza latinetik hartu genuen euskaldunok eta gaztelaniazko* rueda *hitzaren jatorri bera du,* rota*. Hala ere, mendabaldeko Euskal Herrian* bolu *hitza erabili genuen lehenago eta hor dugu* Bolibar*, esaterako. Latinetik hartzea logikoa da erromatarrak heldu aurretik bestelako errotak, eskuzkoak, erabiltzen ziren eta.*



# Intxurtxu

etxebizitza

Aldaerak: Urondo
Ahozkoa:



*43° 10' 35"* *2° 34' 3"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Olaben aurkitzen dugun etxe berri bat da hau, XX. mende amaieran eraikitakoa eta *Intxaurtxuaga* mendipean kokaturikoa. Kokapenari so eginez hartu du izena. Orain arte izen ezagunik izan ez badu ere, auzokoak *Urondo* deitzen zioten, jabearen enpresaren izena, alegia.

Txalet erakoa izan arren, badu Berrizko baserri zaharragoen oihartzunik. Hala, sarrera moduan, erdian atartea dauka, gainean balkoia, eta ganbaran bi leiho, teilatuaren okerdurari egokituak. Lehenengo eta beheko solairuetako izkinetan, leihoak ere baditu. Teilatua bi isurkikoa da.

toponimia

Intxaurtxuaga *toponimoaren ahozko aldaera. Izenaren osagaiak* intxaur *zuhaitz izena, -txu txikigarria eta lekua adierazten duen -aga atzizkia.*



# Iturralde

desagertuta

Aldaerak:
Ahozkoa:




*BUA / Mapa topografikoa, 1933*

Dagoeneko desagertutako baserria dugu honako hau. Antza, XX. mende hasieran desagertu zen, ordura arte baserri honen aipuak jasotzen baitira dokumentu desberdinetan. Horrela Bizkaiko su-erroldetan agertzen da Okango kofradian *Yturralde* (1704 eta 1796) izeneko baserri bat. Hortik aurrera, forma bera mantentzen da dokumentu guztietan: *Yturralde*. Auzotarren artean, ez dugu inolako erreferentziarik jaso baserri honen gainean, eta, horrenbestez, pentsatzen dugu 1905ekoa izan daitekeela azken erreferentzia, hots, *Yturralde* (DJE, 7/ 205. or.).

toponimia

*Izen garden eta arrunta. Gaur egun ez gara konturatzen ura etxera eramatea zen eta horregatik ez dugu behar bezala baloratzen. Antzina lapikoetan eroan behar zen ura eta hori dela eta komeni zen etxea iturrietatik hurbil eraikitzea.*



# Iturritxueta etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa:



*43° 10' 25"* *2° 33' 33"* *Berriz Irudita n / J.A. Ramos*

XXI. mende hasieran eraikitako etxea dugu, *Aransolo* (**Ikus Aransolo**) baserri ingurutik *Armotxa* (**Ikus Armotxa**) baserrira doan bide ondoan kokatzen dena. Inguru horretan izen bereko beste baserri edo eraikin bat omen zegoen, eta hortik hartu du izena. Eremu hori ere izen horrekin ezagutzen da, inguru horretan dagoen iturriagatik.

Etxe berria dugu, zaharragoen egitura imitatuz egina. Zokaloa eta beheko solairuko kantalak harri artifizialekoak dira, eta baoek, berriz, egurrezko dintelak dituzte. Gaineko pisu bakarra egurrezko egitura imitatuz burutu zuten. Bi isurkiko teilatua dauka.

toponimia

*Etxeak izendatzeko modu nagusi bi egon dira, bertako izena hartzea,* Agirre *edo* Aretxega *deituretan bezala, edo etxearen deskripzioa den izen bat sortzea,* Goikoetxe *edo* Errotaetxe *kasuetan ikus daitekeen legez. Gure kasu honetan bertako toponimo zaharra hartu zuten etxea izendatzeko.* Iturritxu *zer den argia da, baina* -eta *atzizkiak esanahi desberdin bi ditu, 'lekua' edo "ugaritasuna".*

# Lekaime Karmeldarrak komentua

Aldaerak:
Ahozkoa:



*43° 10' 6"* *2° 33' 5"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Oraintsu inauguratu berri duten konplexuak 1968an jaso zuten komentua du abiapuntu. Eta honek, 1925ean beste paraje batean sortutakoa, mojek utzi egin zutena sarritan jasaten zituztelako ur handiak. Gaur egungoa oso eraikin funtzionala da, leiho ugari eta handiekin. Agian, zuzenagoa litzateke esatea eraikin bakarra baino, eraikin multzo bat dela, bolumen desberdinez osatutakoa, zaharrak eta berriak ondo baino hobeto integratuta. Bolumen jokoa areagotzeko, hormak pintatu egin dira kolore zuri eta grisekin baliatuz, neurri desberdinetako karratuak egiteko.

toponimia

*Karmeldar orden guztien jatorria Palestinako Karmel mendia da. Bertako kobazuloetara bizitzera joan ziren elizgizon batzuk dira orden honen aintzindariak. Mendia sakratua izan da aintzinetatik eta horregatik bere izena: Jainkoaren baratza. Bertan dago Karmengo ama.*



# Maisu Juan

etxebizitza

Aldaerak: Kuadrena / Olakuetagoikoa
Ahozkoa: Maixú Júan / Koádrena

*"... la casa de Olacueta-goicoa titulada también de Maisu Juan... sita en la barriada de Olacueta, Cofradía de Ocango en Berriz; es de una vivienda teniendo un piso bajo, además de la entrada o portalada un cuarto, cocina y cuadra, y en el principal sala con tres cuartos, pajar y desban; ocupa con el horno y tejavana, y un retazo de huerta contigua, sesenta y ocho estados equivalentes a dos areas, cincuenta y nueve centiareas..."*
*DJE 5/66 or. (1882)*



*43° 10' 9"* *2° 34' 18"* *Berriz Irudi̇tan / J.A. Ramos*

Topatutako lehen arrasto dokumentala 1796koa da, eta urte horretako Bizkaiko su-erroldetan agertzen zaigu: *Maysu Juan*. Hortik aurrera, errolda eta dokumentazio guztietan behin eta berriz errepikatzen da izena, nahiz eta birritan *Olacuetagoicoa* (1849, BAHP, A264/37. or.) izenarekin agertu. Ahozkoan, izen bera mantendu da, hau da, *Maixú Júan*; baina *Koádrena* ere erabiltzen da auzotarren artean. Azken izen hori Ramón Gerediagaren amaren jatorriarekin dago lotuta, Enkarterrietako Kuadra herritik baitzetorren.

XIX. mendeko etxea, orain dela 23 urte inguru guztiz berritu zutena. Harlangaitzaz jaso zuten, eta harlandu ederra erabili zuten kantaletan, beheko solairuko atean eta alde bietan dauzkan leihoetan. Goiko solairuan, berriz, aipagarriak dira balkoiari eusteko lau mentsula luzeak, ia ateburuarekin bat egiten dutenak, eta gaur egun horko hiru baoak harlanduz inguratuta badaude ere, lehen luzituta eta pintatua zeuden, gainerako fatxada guztia bezalaxe.

toponimia

*Hiru izen eduki ditu etxe honek historian zehar, zaharrena eta gaur egun bizirik dena* Maisujuan *da. XVIII. mendean* Maisujuan *izenarekin batera* Olakuetagoikoa *ere ageri da. Beherago zegoen Olakuetarekiko lotura erakusten zuen izen hau. Azkenik, XX. mendean* Koadrena *gehitu zitzaion.*





# Mekolaia etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Mokóla / Mokóla etxésárra



43° 10' 10" 2° 33' 45" *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*"... la casería titulada Marien Mecolaya de Urrecha... en la Cofradía o barriada de Ocango de Berriz, que es de dos viviendas, componiéndose de piso bajo, principal y desban, ocupa una planta solar de doscientos y tres estados con el zaguan, antusano, equivalentes a siete areas y setenta y dos centiareas..."*
*DJE 3/124 or. (1873)*

XVIII. mende hasieratik aurkitzen ditugu *Mekolaia* baserriaren aipuak, 1704ko Bizkaiko suerroldetan jada agertzen baita *Mecolaya*. Hortik aurrera, dokumentu guztietan forma bera mantentzen da, batean izan ezik i latinoaz agertzen baitzaigu: *Mecolaia* (1828, BAHP, A85/16. or.). 1967ko Udal-erroldan, aldiz, ahozko forma jasotzen da, hots, *Mocola*. Berriztarren artean, *Mokóla* eta *Mokóla etxésárra* formak erabiltzen dira baserriari erreferentzia egiteko.

Baserri etxe ederra, handia, bizitza bikoa izandakoa da eta oso bistakoa da hori fatxada nagusian. Izan ere, bi solairu eta ganbaradun eraikinak oso sarrera nabarmenak dauzka ezker eskuman. Bata, arkudun atartea eta bestea, harrizko dinteldun ate zabala. Leihoak ere, saieterez gain, hiru motatakoak dira, harlanduz eginak eta beranduago zabaldutakoak, egurrezko dinteldunak eta luzituak. Eta ganbaran, alderik alde, zurezko balkoia. Hauek guztiak, eta fatxadetan antzematen diren materialak, etxea egin zeneko aldi desberdinen erakusle dira. Esaten denez, parrokia eraiki zutenean erabili gabeko harriak usatu zituzten eta horiek dira etxearen alboko hormari eta arkuaren ondokoari kategoria ematen diotenak, XVI. mendeko tailaren adierazgarri izanik. XVIII. mende akaberan edo XIX. mende hasieran, ostera, gaur egun ikusten duguna burutuko zuten, kontuan izanik bao apalagoak beranduagokoak direla. Oro har, eta batasuna ematen dion goiko balkoia salbu, elkarren ondoko etxe bi dira, eskema antzekoak gidatuta. Atea edo atartea, erdian; gainean, leihoa eta alboetan, leiho bana. Geroago, beste guztiak. Teilatua bi isurkitakoa du.

### toponimia

Mekolaia *edo gaur egun ahoz esaten den bezala* Mokola *etxearen esangura erabat ezezaguna da guretzat. Agian izena loturik dago Zornotzan, Bernagoitia auzoan, eta Lizartzan ageri diren* Mekola *etxe izenekin. Hori horrela balitz amaieran "aldapa" adiera omen zuen* aia *hitza dagoela pentsa genezake.*



# Mekolaiaetxebarria (-a) etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Mokóla etxebarrídxe



*43° 10' 8"* *2° 33' 46"* *Berriz Irudita n / J.A. Ramos*

*Mekolaia* (**Ikus Mekolaia**) baserriarekin lotutako eraikina da hau, 1930eko hamarkadan eraikitakoa. Jatorrizko baserritik hartzen du izena, etxe berria dela adieraziz. Horrela, 1967ko Udal-erroldan *Mocolaechevarri* (BUA, CE) moduan agertzen da. Auzotarren artean, jatorrizko baserritik bereizteko *Mokóla etxebarrídxe* forma erabiltzen dute, nahiz eta maiz etxe biak *Mokóla* moduan aipatzen diren.

XX. mende hasieran egindako baserria, L baten itxurako oinplanoaren gainean, 1979an berritze obrak jaso zituen eta 2011n guztiz berriztatu egin dutena. Gaur egun, fatxada nagusietako hormak harri-bistakoak ditu eta osteetan, berriz, hormak luzituta ageri dira, harlandua kantaletarako bakarrik izanik. Edozelan ere, leiho eta ateburuak dinteldunak dira, hori bai, giltzarri moduko bat dutenak gailenduta. Atartea ertz batean dauka. Solairu bi dauzka eta ganbara. Lehenengo solairuan balkoian jarri dute indarra eta ganbaran, leiho ireki bietan, sasoiko erregionalismoari jarraituz eginak. Egurrezko egitura imitatuz burutu zuten etxea, adreilua eta harrizko mentsulak erabiliaz. Teilatuak bi isuritakoak dira.

toponimia

Mekolaia *izenaz osatutako etxe izena. Esan dugun legez Bizkaian ohikoa da etxe izenetan auzoaren edo zaharragoa zen beste baten izena agertzea eta horregatik Bizkaiko deiturak dira Euskal Herrian luzeenak gure deiturak etxe izenetatik sortu baitziren. Kasu honetan izenaren bigarren osagaiak Mekolaiako etxe barria dela adierazten du.*

# Mendibe

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Mendíbe



43° 10' 17"　　2° 33' 15"　　Berriz Iruditan / J.A. Ramos

*"... la casería rústica titulada Mendive... situada en jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz... y se compone de sus correspondientes pisos cuadras divisiones y habitaciones, comprendiendo en el recinto que ocupan sus paredes ciento tres estados, equivalentes a trescientos noventa y un metros veinte y nueve centímetros..."*
*DJE 2/225 or. (1867)*

*Done Mikel* (**Ikus Done Mikel**) ermitaren parean aurkitzen dugun baserri honen gaineko lehendabiziko erreferentzia dokumentala 1745ekoa da. Bizkaiko su-erroldan Okango auzoaren barruan dagoen baserri bati erreferentzia egiteko erabiltzen da izen hau. Baserri honen izenak ez du inongo aldaketarik jasan urteetan, eta dokumentazioan beti forma berarekin agertzen da, *Mendibe* eta *Mendive* izanik aldaera bakarrak.

1970eko hamarkadan guztiz berriztatutako baserria da, teilatua ere hormigoizkoa daukana, nahiz eta baserri zaharraren harrizko hormak bistaratu dituzten, frontoia luzituta ageri bada ere. Hori izango zen segurutik jatorrizko traza. Gaur egungoaren itxuratik abiatuta, badirudi XIX. mendeko etxearen tankerakoa dela, bi solairu eta ganbaraduna, isuri biko teilatuaren azpian.

toponimia

*Mendi hitz arruntaz eta behe hitzez osatutako izena. Mendi hitzak ez du aparteko eragozpenik, hori bai, gogoan izan behar dugu toponimian mendi hitzak sarritan gaur egun "gain" esaten duguna izendatzeko erabili zela, nahiz eta Andimendi izen ezagunean "mendizerra" esangura duen. Behe hitzari dagokionez A. Irigoienen ustez 'txikia' adiera ere izan zuen. Beraz, aurrekoa ikusita "Gainaren azpian" edo "gaintxiki" adierak izango zituen.*



# Mendikoa

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: **Mendíkua**

*"... la casa también accesoria llamada Mendicua [accesoria de Arangurenazpikoa]... sita en el citado barrio de Ocango de la Anteiglesia de Berriz, que ocupa una planta solar de cincuenta y dos estados, o ciento noventa y siete metros, y se compone su piso llano de zaguan, cocina, un aposento y dos cuadras, y su piso principal de un cuarto, desban y pajar, siendo su construcción de paredes de mampostería por los cuatro costados..."*
*DJE 1/65 or. (1864)*



*43° 10' 41"* *2° 33' 9"* *Berriz Iruditan / A. Arbulu*

Arestian aipatutako *Mendibe* (**Ikus Mendibe**) kasuan bezala, *Mendikoa* baserriaren izenak aldaketa gutxi izan ditu azken mendeetako dokumentazioan. Hasiera batean *Arangurenazpikoa* (**Ikus Arangurenazpikoa**) baserriaren eraikin gehigarria zena XIX. mende erdialdera Berrizko Udalak egindako izendegian *Mendicóa* (1859, BUA, Nmcr) moduan aurkitzen dugu, eta gauza bera gertatzen da XX. mendeko erroldetan ere: *Mendicoa* (1910, BUA, RU) eta *Mendicoa* (1967, BUA, CE). Berriztarrek *Mendíkua* forma erabiltzen dute ahozko transmisioan.

Baserri-etxe trinkoa da, XIX. mendean eta XX. mendearen hasieran ere egiten ziren horietakoa. Hiru pisuz eta ganbaraz osatuta dago, eta fatxadaren antolamendua oso sinplea da, hiru ardatzetan atondu baitziren baoak, txikienak ganbara aldekoak izanik, batez ere izkinetakoak. Atea alde batean dauka, eta hori jasotzeko erabilitako materiala harlangaitza da.

toponimia

*XIX. mendean sortutako etxe honek ez du aparteko azalpenik. Aipa genezakeen gauza bakarra* mendi *hitza bera da. Toponimian* mendi *hitzak, sarritan, gaur egun "gain" esaten duguna izendatzeko erabili izan da, nahiz eta* Andimendi *izen ezagunean "mendizerra" esangura duen.*



# Olabe Baserriak



Berriz Iruditan




BUA / Mapa topografikoa, 1933

## toponimia

*Berriz elizateko Okango kofradian aurkitzen den auzune honetan hainbat baserrietxe aurkitzen ditugu:* Olabebengoetxea *(***Ikus Olabebengoetxea***),* Olabelarrinaga *(***Ikus Olabelarrinaga***),* Olabetxebarria *(***Ikus Olabetxebarria***),* Olabeurigoena *(***Ikus Olabeurigoena***) eta* Olabezubiaga *(***Ikus Olabezubiaga***). Ikusten dugun moduan, baserri guztien izenetan auzo izena agertzen da.* Olabe *izenaren osagaiak argiak dira, ola eta behe, baina gauzak ez dira beti uste dugun bezain gardenak izaten.* Ola *hitzak gaur egun 'burdina lantzeko lekua' bada ere lehenago "kortabasoa", erdaraz "sel", izan zen, eta lehenago "artzainen etxola". Bigarren osagaia behe da, baina Alfontso Irigoienen ustez batzuetan "txikia" esanahia ere izan zuen. Gure kasu honetan "Beheko ola" edo "Olatxua" izan liteke.*



# Olabebengoetxea (a) etxebizitza

Aldaerak: Olabenbengoa / Bengoetxea
Ahozkoa: Bengétxe / Benkétxe / Bengoétxe

*"... la casería de Olave-vengoa y sus pertenecidos radicantes en jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz... en la cofradía de Ocango... es de dos viviendas ocupa con inclusión de la arnaga, horno zaguan y un retazo de huerta y monte contiguos quinientos veinte y cinco estados equivalentes a diez y nueve areas y noventa y siete centiareas... " DJE 4/2 or. (1878)*



*43° 10' 24" 2° 34' 3" Gerediaga Elkartea / T. Angoitia*

Olabeko baserri honen gaineko lehendabiziko aipu dokumentalak 1669koak dira, *Olabe Vengoa* (BAHP, A1261/32. or.), eta Okango kofradiaren baitan agertzen den baserri bati erreferentzia egiteko erabiltzen da izen hau. Dokumentazioan izen desberdinak erabili izan dira, esaterako: *Vengoechea* (1745, Bizkaiko su-erroldak), *Olabe Bengoechea* (1866, DJE, 2/ 41. or.) eta *Bengoeche* (1967, BUA, CE.). Auzotarren artean, *Bengétxe*, *Benkétxe* edo *Bengoétxe* moduan ezagutzen da.

Baserri-etxe handia da. Hiru solairu eta ganbara dauzka, XIX. mendeko baserri askok legez. Fatxada nagusiaren antolamendua simetrian oinarritzen da, nahiz eta baoren baten arrastoak desestali dituzten eta eskuma aldean atea dagoen, ordena hori hautsiz. Hala ere, ardatza nabarmentzeko intentzioa garbia da. Bertan, atarteko arku zoragarriaren gainean balkoia dauka, txikia eta harrizko zoruduna. Horrekin lerrokatuta, bigarren solairuan beste balkoi bat dauka, luzeagoa, egurrezko habeen gainean eraikia.

Gorago, haren ateburua aprobetxatuz, beste leiho txiki bat dago, ganbaran. Ardatz horren bi aldeetara, leiho bina dauka, beheko eta lehenengo solairuetan, eta bakarra, aldiz, bigarrenean. Gaur egun, beheko solairuan harlangaitza desestali egin diote; baina jatorrian goialdean daukan itxura izango zuen, hots, horma luzituak eta pintatuak eta harlandua kantalen eta bao guztien inguruan.

Aipatzekoa da lehenengo solairuko balkoiaren ondoan dauden bi leihoen hegiak molduratuak direla, eta, apalagoak badira ere, baita leiho itsuen antza ere, beheko solairuan gordetzen dituelarik sukaldeko harriaren urak kanporatzeko xurrutarriak. Oso inskripzio interesgarria dauka atarte barruko bi ateburuetan: *"ESTA OBRA Y PAREDES DE LAS HEREDADES POR NOS SANTIAGO MA DE ARGUINZONIZ Y MA DE BE. / SOITA HORMAECHEA DESDE EL AÑO DE 1841 AL 48 Y HEREDEROS VOSOTROS, COMPADECER DE NOSOTROS".*

toponimia

*Sarritan esan dugun legez Bizkaian oso arrunta da etxe izenetan lehenengo osagaia auzoaren izena izatea, hemen bezala (Olabe), eta bigarrena etxearena berarena, Bengoetxea kasu honetan.*

# Olabegoia (-a) etxebizitza

Aldaerak: Olabegoikoetxea / Goikoetxea
Ahozkoa: Olabegóia / Goikétxe



*43° 10'27"* *2° 34'5"* *Berriz Irudıtan / J.A. Ramos*

*"... la casa titulada Olavegoya... en la Cofradía de Ocango, de la anteiglesia de Berriz, ocupa una planta comprendidos los aleros del tejado de noventa y dos estados cuadrados equivalentes a tres areas y cincuenta centiareas. La tejabana que se halla pegante a ella, contiene diez y ocho estados... el horno que se encuentra frente de la casa mide cinco estados... otra tejabana nombrada vulgarmente garaya que se halla también frente de la casa contiene catorce estados..." DJE 7/28 or. (1902)*

Bizkaiko su-erroldetan *Goikoetxea* moduan agertzen den baserri honek izendapen desberdinak izan ditu urteetan zehar, hala nola *Olabe Goicoechea* 1745eko Bizkaiko su-erroldan, *Olabe Goia* (1771, BAHP, A190/1. or.), *Olabegoya* (1857,BUA, Viv) eta *Goicoeche* 1967an Udalak eginiko etxebizitzen erroldan. Auzotarren artean, *Olabegóia* edo *Goikétxe* erabiltzen dira.

Aldaketa handiak jasota dituen baserri-etxea da, eta bi momentu arkitektoniko behintzat igartzen zaizkio. Askotan ikusten ditugun hiru gorputzak bistan daude honetan ere; baina aldeko biak oso desberdinak dira erdikoarekin konparatzen baditugu, oso ondo integratuta dauden arren. Aldamenetakoak oso harlandu bereziaz jasota daude; XVI. mendean, aldiz, kalitateko eraikinetan asko zabaldu zen silarria erabilita. Erdialdeak, aldiz, XIX. mende hasierako itxura dauka, atarte zabalarekin, sarrerako arkuarekin, gaineko balkoi txikiarekin, harrizko zorua daukana, eta alboetako leiho banarekin.

Gorago, seguruenik orduko berrikuntzan jasotako solairua dago. Bertan, balkoi luzea dago, erdialdearen alderik alde doana eta alboetako leihotxoak ere barne hartzen dituena. Erdialdean hormak zuriz pintatuta daude, eta bao guztiak harlandu ederrez inguratuta. Alboko bi gorputzetan desberdintasunak sumatzen dira. Hasteko, ezkerraldekoa estuagoa da, eta leiho bana dauka solairuko, goikoaren hegia molduratua izanik. Eskumako aldea, ostera, zabalagoa da, eta bi leiho ditu solairu bakoitzean, lerrokatuta ez badaude ere. Gainera, alde horretako etxe-kantalak ez dira garbiak, etenda baitaude, atxikitako terrazaren azpikoak ondo islatu bezala.

toponimia

*Sarritan esan dugun legez Bizkaian oso arrunta da etxe izenetan lehenengo osagaia auzoaren izena izatea, hemen bezala (*Olabe*), eta bigarrena etxearena berarena,* Goia *kasu honetan.*



# Olabelarriñaga

etxebizitza

Aldaerak: Larrinaga
Ahozkoa: Larréña / Larríña

*"... la casería de Olabe-larrinaga... situada en la Cofradía de Ocango de la Anteiglesia de Berriz que es de una vivienda, ocupa una planta solar de ciento diez estados cuadrados equivalentes a cuatro areas y diez y nueve centiareas... en la planta van incluidos el horno y el zaguan..."*
*DJE 3/134 or. (1877)*



*43° 10' 34"* *2° 33' 57"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Bizitza bakarreko baserri honen gaineko lehen arrasto dokumentala 1653koa da: *Olabe Larrinaga* (BAHP, A750/32. or.). Bertan, Okango kofradiaren baitan agertzen den baserri bati erreferentzia egiteko erabiltzen da izena. XVIII. mendean zehar beti *Olabe Larrinaga* (BAHP, A45/1. or.) aurkitzen dugu, eta Bizkaiko suerroldetan ere horrela agertzen zaigu. Alabaina, XIX. mendetik aurrera, forma horrekin batera *Larrinaga* forma ere agertzen da, hala nola 1825eko polizia-erroldaren kasuan. XX. mendean, eta batez ere udal-agerietan, *Larrinaga* (1967, BUA, CE) erabili izan da.

Gaur egun, guztiz itxuraldatutako baserria da. Behealdea zeharo itsututa badu ere, oraindik antzeman daiteke berezko egitura, nahikoa elementu kontserbatzen dituelako hurbilpen bat egin ahal izateko. Sarritan ikusten ditugun hiru gorputzak honetan ere badaude, nahiz eta erdialdekoa (atartearena) iraganean zena baino txikiagoa den, zutikoaren eskumako aldea itxi egin dutelako.

Ezkerraldeko gorputza da sendoena, eta harlandu dauka kantaletan, baita atarteko egurrezko dintelari eusteko janban ere. Beste aldean, berriz, ez zegoen holakorik, goitik beherako tantaiak zehazten zituztelako ertzak, Asua (**Ikus Asua**) baserrian moduan. Hormak, harlangaitz itxurosozkoak dira bi aldeetan. Erdialdean egurrezko egitura dauka, baita leihoak ere, eta tarteko hormak, aldiz, luzituta ditu eta margotutako harlangaitzez egindakoak. Frontala hutsik dago, baina bi isurkiko teilatuari eusten dioten gailurra eta habea bistan ditu. XVI. mende bukaerakotzat jotzen da baserria, baina hamarkada batzuk beranduagoko ezaugarriak ditu.

toponimia

*Sarritan esan dugun legez Bizkaian oso arrunta da etxe izenetan lehenengo osagaia auzoaren izena izatea, hemen bezala (*Olabe*), eta bigarrena etxearena berarena,* Larrinaga *kasu honetan.* Larrinaga *deitura nahiko arrunta da eta osagaiak* larrain *"garia jotzeko lekua", mendebaldean* larrin *moduan ezagutua, eta tokia adierazten duen* -aga *atzizkia dira.*





# Olaberreka etxebizitza

Aldaerak: Santiena
Ahozkoa: Sántidxena



43° 10' 9"    2° 34' 20"    Berriz Irudiitan / J.A. Ramos

*"... la casería de Olabe-erreca y sus pertenecidos radicantes en jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz... situada en el barrio de Ocango... es de un piso bajo y alto, contiene con inclusión de su huerta y zaguan ciento setenta y dos estados equivalentes a seis areas cincuenta y cuatro centiareas..."*
*DJE 4/10 or. (1878)*

Bizitza biko baserri honek *Olabebengoetxea* (**Ikus Olabebengoetxea**) baserriarekin erlazio estua izan du, familia bereko kideak izanik. Inguruan pasatzen diren uren izena hartzen du honako honek, eta dokumentazioan hala izendatzen da. *Olabe Erreca* (1796) moduan aurkitzen dugu XVIII. mende amaierako su-erroldan. Aldaketa gutxi jasan ditu, eta XIX. mendean ere, *Olave-erreca* (1825, PE/1825) moduan erregistratzen da 1825eko polizia-erroldan. XX. mende hasieran, ahozko forma jasotzen da zenbait dokumentutan, hots, *Santiena* (1905, BUA, 40. or.), eta azken erroldetan *Olabarreca* (1967) bezala agertzen da berriro ere. Berrizen *Sántidxena* moduan ezagutzen da, garai baten jabea izandako Santiago Arginzonizen izenetik datorkiona.

Berriz inguruan XVII. mendean hain hedatuta zegoen trazan jasotako baserri etxea da, bizitza bikoa, ohiko hiru gorputzekin, ondoan beranduago atxikitako beste eraikin bat daukan arren. Oso gutxitan ikusten diren goitik beherako harlanduzko horma sendoak dauzka aldamenetan, bat egiten dutenak beheko solairuko alboko gorputzekin. Hauetan harri eskasagoa erabili zuten hormetan eta harlandua, eskumako leihoan. Erdian, sarritan ikusten dugun atartea dauka, egurrezko dintelduna, janbetako harkantoietan jarritakoa. Lehenengo solairu guztia eta ganbara, egurrezko egituraz armatu zen, tarteak adreiluzkoak eginaz. Horietan zabaldu ziren leihoak eta ganbara aldekoa hutsik utzi zuten, karel lana egiten duena ezik. Beranduago, atartearen gainean balkoia egin zuten, gaur egun jausita dagoena. Bi isuritako teilatudun etxea da, hegal zabalekoa eta horretarako egurrezko besoak egin zizkioten, bere horretan mantentzen direnak.

### toponimia

*Sarritan esan dugun legez Bizkaian oso arrunta da etxe izenetan lehenengo osagaia auzoaren izena izatea, hemen bezala, eta bigarrena etxearena berarena,* Erreka *kasu honetan. Nahiz eta gaur egun* erreka *hitza "ibai txikia" aipatzeko erabili, antzina ez dela, urari latsa esaten zitzaion eta latsak osatzen zuen haranari* erreka*.*



# Olabetxebarria (-a)

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Olabetxebárri

*"... la casa titulada Olabe-echevarria accesoria de la anterior [Olabe-larrinaga], la principal... en dicha cofradía de Ocango que es de dos viviendas, ocupa con inclusión del horno, zaguan, un pequeño campo y un retazo de huerta contiguos, doscientos treinta y siete estados o nueve areas y dos centiareas..."*
*DJE 3/134 or. (1876)*



*43° 10' 30"* *2° 33' 59"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Garai batean Olabe auzoan egindako etxe berria izango zen honako hau. Dokumentazioan, XVIII. mende hasieran izaten dugu honen berri: *Olabe Echevarria* (1708, BAHP, A2160/32. or.). Hortik aurrera, aldaketa gutxiko izena du, eta beti izen bera aurkitzen dugu, forma desberdinak erabili arren: *Olabe Echebaria* (1796) mende amaierako su-erroldan, *Olabe-echevarria* (1876, DJE, 3/ 134. or.) jabego-eskrituretan eta *Olavechevarri* 1967ko Udal-erroldan. Olabetarren artean, *Etxebárri* deitzen dute, eta berriztarren artean, *Olabetxebárri* da gehien erabilitako forma.

Zaharragoaren lekuan eraikitako baserri berria da, lehengoaren tankera nagusia gordetzen saiatu badira ere. Isuri biko teilatuaren azpian erdiko ardatzaren arabera antolaturiko fatxada aurkezten du. Beheko solairuan alboetako leiho banak atartea indartzen dute. Eta lehenengo solairuan, ostera, balkoi zabala da arreta erakartzen duena, egurrezko karelduna. Ganbaran ere balkoia dauka, baina txikiagoa. Alboetan, txori-tokiak. Etxearen barrenean, zokalo gisa, harria erabili dute, baita kantaletan eta atartearen janbetan ere edo alboetako fatxadetako leihoen ertzetan. Gainerakoa luzitu eta margotuta du.

toponimia

*Sarritan esan dugun legez Bizkaian oso arrunta da etxe izenetan lehenengo osagaia auzoaren izena izatea, hemen bezala, eta bigarrena etxearena berarena,* Etxebarria *kasu honetan.* Etxebarria, *erdi-ekialdeko* Etxeberria *aldaerarekin batera Euskal Herriko deiturarik hedatuena da.*

# Olabeurigoena (-a) etxebizitza

Aldaerak: Urigoen
Ahozkoa: Uríon / Uríongoikue / Uríonbekue



43° 10' 28" 2° 34' 2" Gerediaga Elkartea / T. Angoitia

*"... la casería llamada Olaveurigüen... en termino de la anteiglesia de Berriz, es de dos viviendas compuestas la una en el piso bajo de cocina, tres cuartos y cuadra, y en el superior de un cuarto, dos camarotes y pajar; la otra en el bajo de cocina y cuadra, y arriba de una sala, dos cuartos, camarote y pajar, ocupando una planta solar de trescientos treinta y cinco estados... al frente de la casa existen dos arnagas o accesorias y un horno con los zaguanes y antusanos..."*
*DJE 5/174 or. (1886)*

Bizitza biko baserri honen aipuak Bizkaiko su-erroldetan agertzen zaizkigu: *Urigen* (1704) eta *Vrigen* (1745). XVIII. mende amaieran *Olabe Urigoen* (1798) BAHP, A98/8. or.) aurkitzen dugu, nahiz eta XIX. mendeko errolda bitan *Urigoen* agertu (1825eko polizia-errolda eta Berrizko Udalak egindako eraikinen zerrenda). Nonbait *Olabe* galdu eta izenaren bigarren osagaia nagusitzen da aipu gehienetan: *Urigüen* (1865) DJE, 1/ 152. or.) eta *Urigüen* (1905, BUA, 40. or.). Auzotarren artean *Uríon* moduan ezagutzen da, eta bertakoek baserri-etxeak dituen bizitza biak ere bereizten dituzte: ezkerrekoa *Uríongoikue* eta eskumakoa *Uríonbekue*.

Sasoi desberdinetako aldeekin osatutako eraikina da. XVI. mendeko etxe baten parte inportanteak kontserbatzen ditu oraindik, egoki integratu direnak XVIII. mende akaberan edo XIX. enean jasotako baserrian. Bai ostean, bai fatxada nagusiko eskuma aldean, ondo baino hobeto nabarmentzen dira Errenazimenduan erabili zen silarri bereziekin egindako hormak, edo molduradun hegiak dauzkaten leihoak. Beste aldea mende batzuk beranduagokoa da. Alde hau orduko etxe onen eran egin zen. Fatxada antolatzeko modua erabat simetrikoa da, ardatz moduan atarteko arku zabala hartuta. Sarri gertatu moduan, gainean balkoi txikia dauka, eta ganbara aldean zabalagoa, burdinazko eta zurezko kareldunak besteak beste. Aldamenetan, leihoak, eta txikienak, ganbarakoak, hau ere ohiturari jarraituz. Alde berriago honetan harlandua kantal eta bao guztien ertzak egiteko utzi zuten, harlangaitza hormetan erabiltzen zuten bitartean, etxe zaharragoan ez bezala. Bi isuritako teilatuak batzen ditu bi aldeak.

toponimia

*Sarritan esan dugun legez Bizkaian oso arrunta da etxe izenetan lehenengo osagaia auzoaren izena izatea, hemen bezala, eta bigarrena etxearena berarena,* Uriogoena *kasu honetan.*



# Olabezubiaga

etxebizitza

Aldaerak: Zubiaga
Ahozkoa: Subídxa

*"... la casería titulada Olabezubiaga, en el termino de la anteiglesia de Berriz, en el barrio de Ocango... que ocupa una superficie de noventa y cuatro estados cuadrados equivalentes a tres areas cincuenta y ocho centiareas..."*
*DJE 4/230 or. (1880)*



*43° 10' 31"* *2° 33' 59"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*Olabe* auzoko baserriak modura, honako honek ere izen konposatua du. Dokumentazioan aldaketarik gabe erregistratu da mendeetan. XVII. mendean aurkitzen ditugu lehen aipuak, *Olave Zubiaga* (1683, BAHP, A2263/32), eta hortik abiatuta gaur arte izen bera mantendu izan da, *Olabezubiaga* (1865, DJE, 1/ 152. or.). Auzoan, beste hainbat lekuetan gertatzen den moduan, bigarren zatia baino ez dute erabiltzen, *Subídxa*, horrekin nahiko izaten da Olabeko *Zubiaga* edo *Olabezubiaga* baserria identifikatzeko.

Bateratuta dauden etxe bik osatutakoa da gaur egun: bata, aurrekoa, 1800 inguruko estiloan jasoa, eta bestea, ostera, tradizioan oinarritutako estilo berrian. Zaharragoan goranzko tendentzia da nagusi. Baoak hiru ardatzetan antolatzen dira, eta itxura simetrikoa badu ere, ezkerraldea estuagoa da. Erdiko ardatza indartzen dute sarrerako ateak, gaineko leiho luzeak eta ganbarako balkoi zabal bakarrak. Jatorrian etxea luzituta egongo zen, gaur egun ganbara aldean ikusten den moduan, eta harlandua erabili zuten kantalak eta bao guztiak indartzeko. Berri-berria da atzean itsatsita dagoen etxea. Horretan ere erdialdea da nagusi, XVII. mendeko etxeetan legez, zura-imitaziozko egiturarekin egina. Alboetan, horma estaltzeko harria erabiltzen den bitartean, egurra erabili dute baoak egiteko. Aurrekoan ez bezala, honetan horizontaltasuna da gidari.

toponimia

*Sarritan esan dugun legez Bizkaian oso arrunta da etxe izenetan lehenengo osagaia auzoaren izena izatea, hemen bezala, eta bigarrena etxearena berarena,* Zubiaga *kasu honetan.* Zubiaga *leku izena nahiko arrunta da nahiz eta lehen zubiak orain bezain arruntak ez izan eraikitzea garestia zelako.*

# Olabezubiaurre etxebizitza

Aldaerak: Augustoen Zerrea
Ahozkoa:



*43° 10' 8"* *2° 34' 18"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*"... la casería nombrada de Olavezubiaurre, su accesoria y pertenecidos radicantes en la Anteiglesia de Berriz... es de una vivienda y consta de piso bajo, con cocina y cuadras, y de principal compuesto de cuartos para habitar, pajares y desban. La casa accesoria... es también de una vivienda; compuesta de cocina y cuadras en el piso bajo y en el principal de cuartos, pajares y desban. Ambos edificios con sus zaguanes, antusano y un retazo de huerta ocupan doscientos cincuenta y tres estados..."*
*DJE 4/61 or. (1880)*

Topatutako lehen arrasto dokumentala 1728koa da, eta bertan Okango kofradiaren baitan agertzen den baserri bati erreferentzia egiteko erabiltzen da izen hau, hau da, *Olabe Zubiaur* (BAHP, A1350/32. or.). Hortik aurrera, errolda guztietan behin eta berriz agertzen den baserria da eta izen bera mantenduz gainera, oso aldaketa gutxirekin: *Olavezubiaurre* (1878, DJE, 4/ 61. or.), *Olavezuviaur* (1896, DJE, 6/ 216. or.) eta *Olavezubiaurre* (1939, BUA, 37. or.). Egia da, azken urteetan eta jabearen ogibidea zela-eta, baserri hau *Augustoren Zerrea* moduan ezagutu dela. Egun, baserriaren aurrealdean oraindik ikusi ahal da zerrategia hartzen zuen teilapea.

Errota egondako lekuan egin zuten baserria, guztiz eraberritu dutena oraintsu, hainbat elementu dotoretuz. XIX. mendeko etxeen eredu da, lau isurkiko teilatuarekin. Harlangaitzaz jasotakoa da, luzitzeko asmoz jarri zutena, nahiz eta gaur egun materiala bistan duen. Beheko solairuko baoak modu irregularrean jarrita daude, hormigoizko dintelekin hornituta lehenengoan, ganbaran ez bezala. Izan ere, solairu horietan gaineko leihotxoekin lerrokatuta daude pisu nagusiko izkinetako leihoak eta erdialdeko balkoiak. Leihoburu guztiek dintel berriberria daukate, harrizko dobelarekin.

## toponimia

*Sarritan esan dugun legez Bizkaian oso arrunta da etxe izenetan lehenengo osagaia auzoaren izena izatea, hemen bezala, eta bigarrena etxearena berarena,* Zubiaurre *kasu honetan.* Zubiaurre *leku-izena nahiko arrunta da zubiak oso leku garrantzitsuak baitziren.*



# Olakueta etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Palásixue

*"... la casa palacio de Olacueta... en termino de Berriz, confina por Oriente, Mediodia y Norte con la huerta propia y franquicias correspondientes a la casa llamada del Sacristán y horno común a esta casa y al mismo palacio; consta de tres pisos, piso llano y desban. El horno se halla entre la casa palacio y la casa del Sacristán y es comun a ambas casas: la planta solar contiene cincuenta y cinco y medio estados..."*
*DJE 5/235 or. (1888)*



*Berriz Iruditan*

Berriztik Elorriora doan bide ondoan kokatzen zen jauregia dugu honako hau, *Zalduerreka* ondoan, egun Eitua, Okango eta Murgoitio kofradiek bat egiten duten eremuan. XVIII. mende amaieran dugu honen berri dokumentazioan, hots, *Olaqueta* (1795, BAHP, A28/7. or.). XIX. mendean forma bera mantenduko da: *Olacueta* (1825, PE/1825), *Olacuéta* (1859, BUA, Nmcr) eta *Olacueta* (1905, BUA, 40. or.). XX. mendean *Palacio de Olacueta* (1939, BUA, 37. or.) eta *Palacio* (1967, BUA, CE) aipuak agertzen dira, besteak beste. Jauregi honen eraginez, Berrizko beheko auzoa Olakueta izenez ezagutuko da. Horrez gain, trena herrira heldu zenean, bertako geralekuak *Berriz-Olakueta* izena hartu zuen. Herritarren artean, *Palásixue* moduan ezagutu izan da. XX. mendearen bigarren erdian, Bilbo-Baiona autopistaren eraikuntzarekin, *Olakueta* jauregia desagertu egin zen.

XVIII. mende amaieran zabaltzen hasi zen estiloan egindako jauregia zen Olakuetakoa, eta Azkoitiko Insausti etxearen antza ere sumatzen zitzaion, hain arkitektura kultukoa ez bazen ere. Sotoak, bi solairu eta ganbaraz osatutakoa zen. Simetria ardatzaren arabera ordenatu zen bere fatxada, baina erdialdea indartuz, eskailera monumentalaren bidez eta ganbarako txapitula edo frontoia nabarmenduz. Horma zuriek eta ertz guztietako harlanduek oso efektu koloretsua emango zioten jauregiari.

toponimia

*Berriz, herri izena izateaz gain, Deustuko auzo bat denez, inori bururatu zitzaion geltokiak ez nahasteko Berrizkoari Berriz-Olakueta jartzea, zentzuzkoena Berriz-Deustu jartzea bazen ere Berriz udala baita. Horren ondorioz etxe dotore baten izenak berebiziko garrantzia hartu zuen. Itxuraz izenaren osagaiak argiak dira, ola, hemen 'burdina lantzeko lantegia' adierarekin, -ko inguruan ahoz-ku bihurtzen dena, eta hainbatetan aurkitzen dugun -eta atzizkia. Baina zail da ko > ku aldaketa hau XVIII. mendean aurkitzea eta hori gutxi balitz mende horretan, behin baino ez bada ere Olakurueta ageri da 1799an etxe berriak aipatzean.*

# Ortuondoa (-a) etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa:



*43° 10' 7"* *2° 34' 15"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Bi bizitzako eraikin hau autopista egin aurretik eraiki zen, duela 50 urte gutxi gorabehera. Berriztik Zaldibarrera doan errepidearen bazterrean kokatzen da, eta urteotan ez zaio ezagutu inongo izenik. Jabeekin berba egin ostean eta eskriturak begiratuta, ikusi genuen *Olabezubiaurre* (**Ikus Olabezubiaurre**) baserriaren *Ortuondo* soroan eraikita zegoela, eta orduan erabaki zen *Ortuondo* izena hartzea eraikina identifikatzeko.

XX. mende erdialdean eraikitako etxea, Berriz inguruko aurreragoko baserrien tradizioan oinarrituta. Fatxada guztiz simetrikoa da eta erdiko ardatza du indartua. Beheko solairua harlanduaz burutu zuten. Erdian arkudun atartea dauka eta alboetan, leiho bana. Inposta marra batek bereizten du lehenengo solairutik, hortik gainekoa luzituta dagoelako. Lehenengo solairuan erdialdean balkoi luzea du, zementuzko karel itsu batekin, eta alboetan, ohiko leihoak. Ganbara aldean, bi leiho. Leiho guztiak plaka batek inguratzen ditu. Beheko solairukoena harrizkoa da eta goikoena, berriz, porlanezkoa. Denek daukate giltzarria gailenduta.

toponimia

*Batzuetan izen txikiak, etxekoak, sarritan mapa batean agertuko ez zirenak handi bihurtzen dira eta hori da etxe honen kasua. Toponimo txiki eta arrunta den* Ortuondo *nagusi bihurtu zen etxe bat bertan eraiki zenean.* Ortu *hitza latineko* hortus *hitzetik etorri zen, gaztelaniazko* huerto *bezala, baina Mendebaldean baino ez da erabiltzen, gainerako Euskal Herrian* baratza *baita erabiltzen den hitza.*



# Ospitalea

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Hospíttela / Ospíttela

*"... una casa destinada a Hospital, situada en el barrio de Olacueta... en jurisdicción de Berriz: que se compone de piso llano principal y camarote, ... Ayuntamiento de la anteiglesia de Berriz... viene poseyendo a título de dueño quieta y pacíficamente la finca de este numero desde tiempo inmemorial, sin que conste de los antecedentes obrantes en el archivo de aquel municipio de qué persona ó Corporación se adquirió, destinándose hoy a Hospital..."*
*DJE 9/29 or. (1913)*



*43° 10' 9"* *2° 34' 19"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Lehenago eraiki bazen ere, batez ere XX. mendean aurkitu izan ditugu etxe honen gaineko aipamenak: *Hospital* (1905, BUA, 40. or.) eta *Hospital* (1967, BUA, CE). Ikusten denez, agerietako aipamenetan ez du inongo aldaketarik izan. Auzotarren artean, *Hospíttela* eta *Ospíttela* ahozko formak dira erabilienak.

Izenak adierazi moduan, garai batean ospitalea izandakoa da. Errege-bidearen ondoan zegoen, eta ostatu edo atseden hartzeko premia zutenentzako babeslekua zen. Egurrezko egiturak Berrizko beste etxe asko gogorarazten ditu. Aitzitik, etxearen alboak egituratzen dituzten goitik beherako harrizko hormek lotura garbia daukate *Olaberreka* etxearekin (**Ikus Olaberreka**), nahiz eta hura handiagoa den. Izan ere, eraikin hau tankera horietakoak baino estuagoa da, eta atartea eskuman dauka, erdian barik. Horregatik, alde horretako horma angeluari doitzen zaio, atarteko egurrezko dintelaren janba gisa jarduteko, kalitate oneko silarriekin hornituta.

Beheko solairuko beste aldea harlangaitzaz eraiki zuten, erdian daukan leihoaren ertzak eta janbaren kantalak izan ezik. Arestian esan moduan, gaineko solairua eta ganbara egurrezko egitura daukate. Lehenengoak hiru leiho ditu, erdikoa balkoi bihurtu dutela, eta ganbaran, berriz, txori-tokiak ikus daitezke. Tarteko hormak luzituta eta zurituta daude. Bi isurkiko teilatua du, eta hegal zabalari eusteko, zurezko habeak.

toponimia

*Gaur egun zail da asmatzea zer nolako baliabide eskasak zeuden herrietan eritasunak sendatzeko. Sarritan ospitale bat egoten zen, gaur egungo ospitaleekin zer ikusi gehiegi ez zuena. Herriarenak baziren ere kasu askotan ongile batek utzitako doaitza bati esker bizi ziren ospitale hauek. Antzina herri guztietan egoten zen ospitale bat, askotan ermita bati atxikia, herrikoak eta atzerritarrak babesteko. Etxe xumeak eta baliabide eskasekoak ziren baina sendatzeko aukera bakarra zen.*



# Ospitaleaurrea (-a) desagertuta

Aldaerak:
Ahozkoa: Ospíttelaurre / Hospíttel áurrie
Ebáristona / Kastéllano txikíxena




*BUA / Mapa topigrafikoa, 1933*

*"... la casa accesoria de la casería principal de Olabe Zubiaurre u Hospital-aurre, radicante en la barriada de Olacueta, en jurisdicción de la anteiglesia de Berriz, que es de una vivienda... compuesta de cocina y cuadra en el piso bajo y en el principal de cuadras, pajares y desvan, ocupa de planta treinta y tres estados cuadrados equivalentes a una area y veintiséis centiareas..."*
*DJE 6/221 or. (1896)*

Izenak erakusten duen moduan, *Ospitalea* (**Ikus Ospitalea**) eraikinaren aurrealdean kokaturiko etxea zen honako hau, *Olabezubiaurre* (**Ikus Olabezubiaurre**) baserriaren atzeko aldean. Orain dela 55 urte inguru baserri hau erre eta desagertu egin zen. Dena den dokumentazioan erregistratuta aurkitzen dugu XIX. mendetik: *Hospitaleaurre* (1847, BAHP, A833/20), *Ospitaleaurrecoa* (1853, BAHP, A3474/23. or.), *Hospital-aurre* (1896, DJE, 6/ 221. or.) eta *Ospital aurre* (1939, BUA, 37. or.).

toponimia

*Azalpen berezirik behar ez duen izena* Ospitale *(***Ikus Ospitalea***) izeneko etxearen aurrean eraikia.*



# Ospitaleondoa (-a) etxebizitza

Aldaerak: Olabe
Ahozkoa: Ospítalondo

*"... la casa rústica titulada de Olabe... situada en jurisdicción de la anteiglesia de Berriz, que comprende veinte y dos estados, equivalentes a ochenta metros de cabida, y la que se compone de sus correspondientes pisos, cuadras, divisiones y habitaciones..."*
*DJE 3/17 or. (1871)*



*43° 10' 9"* *2° 34' 18"* *Berriz Irudita n / J.A. Ramos*

Baserri honen gaineko lehen aipua 1825ekoa da. Polizia-erroldan agertzen zaigu, Okango auzoaren barruan, *Pegante al Hospital*, hau da, *Ospitale* etxearen (**Ikus Ospitalea**) ondoan, dagoen etxe bati erreferentzia egiteko. 1905. urtean *Junto Hospital* (BUA, 40) erreferentzia aurkitzen dugu, eta 1967ko Udal-erroldan, aldiz, *Hospital ondo* (BUA, CE). Berriztarren artean, *Ospítalondo* da formarik erabiliena.

Oso baserri-etxe soila eta estua da, seguruenik XIX. mendekoa. Hiru pisutan banatuta dago, eta gaur egun bizitza bikoa da, lehen bakarrekoa bazen ere. Fatxada ere sinplea du, lizituta eta pintatuta, harlanduzko kantalekin. Beheko solairuan, harlanduz inguratutako atea dauka alde batean, eta leiho bi. Goikoan, berriz, balkoia ikusten dugu erdian, eta leihoak, berriz, alboetan; denak enfoskatuta. Gorago, gero altxatutako ganbaran, egurrezko balkoi luzea dauka.

toponimia

*Izen gardena antzinako* Ospitalearen *ondoko ingurua izendatzen duena (***Ikus Ospitale***).*





# Sagarminaga

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Sámina / Sármina




43°10'10" 2°33'7" *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Berriz eta Zaldibar arteko mugan kokaturiko baserri honen lehen arrasto dokumentala 1745ekoa da, eta bertan Okango kofradiaren baitan agertzen den baserri bati erreferentzia egiteko erabiltzen da *Sagarminaga* (Bizkaiko suerroldak) izena. Hortik aurrera, errolda guztietan behin eta berriz agertzen da izena, inolako aldaketak jasan barik: *Sagarminaga* (1825 eta 1967). Azken hamarkadetan geltokiko taberna egon da bertan, oraindik kontserbatzen dena.

Eraikin honen parean, lehengo tren-geltokia zegoen. Baserri honen hormak markatzen du Berriz eta Zaldibar arteko muga. Auzotarren artean, *Sámina* edo *Sármina* dira formarik erabilienak ahozkotasunean.

Baserri-etxe apaina dugu, 1900. urte inguruan kaleko etxe asko egiten ziren tankeran jasoa. Bi bolumen bereizten dira: batak bi solairu eta ganbara ditu, eta bestean azken hori falta da. Horma guztiak luzituta eta margotuta daude, eta pisuak banatzeko, inposta-plaka bat dauka luzetara fatxada guztian zehar, bi bolumenak berdinduz. Fatxadaren aipagarriena ezkerraldeko bolumenean dagoen begiratokia da, lehenengo solairuaren erdian, sarrerako atearen gainean.

Beste bao guztiak leihoak dira, denak lerrokatuta, eta plaka batek markatuta, txikienak ganbarakoak izanik. Ezkerraldeko bolumenean taberna jarri zuten, eta aldamen batean, kanpoaldeari atxikita, sarrerako eskailerak ditu. Azken 50 urteetan, obra gutxi jasan ditu, margoketa-lanak gehienbat.

## toponimia

*Izen hau leku baten baino gehiagotan ageri da baina ez dago esangurari buruzko adostasunik. Batzuek uste dute* sagarmin *eta* -aga *direla osagaiak. Sagarminak basoko sagarrak dira eta ez dira gozoak izenak dioen bezala. Hala are, sagarmina "sagar mintegia" da eta* pagomina *"pago mintegia".*



# Done Mikel

ermita

Aldaerak: San Miguel
Ahozkoa:



43°10'19" 2°33'15" *Berriz Iruditan / A. Arbulu*

Done Mikel goiangeruarekiko jaiera edo debozioa oso zaharra da gure artean. Arrunki santuak izaten dira hil ostean zerura joandakoak, baina Done Mikel goiangerua da, aingeruen artean goren dagoena eta Elizaren zaindaria da. Horregatik margo eta estatuetan ezpata eskuan ageri da. Horretaz gain Azken Epaiketaren margoetan ageri da arimak pisatzen. Jai eguna irailaren 29an da. XVI. mendean egin zen Trentoko kontzilioak ekarri zuen santuen euskarazko izenak baztertzea eta erdarazkoak nagusitzea horregatik Bizkaian ohikoa izan da jatorrizko Mikel izenaren ordez euskaraz ere gaztelaniazko Migel erabiltzea.

Zaldibarko parrokiaren ardurapekoa bada ere, Okangon dago goiaingeruari dedikatutako ermita ederra. Luzanga da, neurri onekoa eta kanpai-horma ere badu, eraikina baino berriagoa. Elizpeak L forma hartzen du, alde bitan bakarrik dagoelako banatuta. Oso interesgarriak dira elizpeko teilatuari eusteko harrizko pilare klasikoak, zokaloaren gainean eutsitakoak. Ermiten artean, elementu arkitektonikorik zaharrenetarikoak kontserbatu dituena dugu hau. Izan ere, leiho konopiala dauka eta dobela politeko arkua sarreran, eta, tarteka oso kalitate oneko harlanduaz burututa dago, bat etorriko zena aurreko elementuak egin zireneko garaiarekin, XVI. mende inguruan.





# Torretxu

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Torrétxo



43° 10' 10" 2° 34' 8" *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*"... la casería de Torrechu situada en el barrio de Ocango de la anteiglesia de Berriz... es de una vivienda y se compone de un piso bajo y otro alto de cabida de doscientos y un estados o sea setecientos y cinco metros..."*
*DJE 6/140 or. (1892)*

Berriztik *Done Mikel* (**Ikus Done Mikel / San Migel**) ermitara doan bide ondoan dagoen baserria da honako hau. Dokumentazioan, XVIII. mendeko azken su-erroldan agertzen zaigu *Torrechua* (1796, Bizkaiko su-erroldak). Ia aldaketarik izan ez duen izena da. XIX. eta XX. mendeetan agertzen diren aipuetan ere aldaera gutxi ezagutuko ditugu, -*chu* edo -*cho* amaierarekin agertzea izango delarik aldaketa bakarra: *Torrecho* (1825, PE/1825), *Torrechu* (1892, DJE, 6/ 140. or.) eta *Torrecho* 1967ko Udal-erroldan. Auzotarren artean, *Torrétxo* forma darabilte ahozko jardunean.

XVIII. mende amaierako edo XIX. mende hasierako baserri-etxea, ia desagertzeko zorian egon dena. Hiru isurkiko teilatuaren azpian, harlangaitzaz jasotako eraikina dugu, luzituta eta pintatuta, nahiz eta dinteldun atea eta leihoak harlanduzkoak eduki. Hiru ardatzetan zeukan fatxada antolatua, atea erdian izanik. Gaur egun, ganbaran hormigoizko balkoia dauka.

toponimia

*Nahiz eta euskarazko hitz hedatuena* dorre *izan, Bizkaian* torre *erabili izan da eta horrela ageri da etxe izenetan. Dorre hauek XIV. mendeko gerretan erabili ziren baina mende horren amaieran bakeak ekarri zuen haien gainbehera eta azkenean etxe bihurtu ziren ateak eta leiho zabalagoak eginez.*



# Ugartezabala (-a) etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Sabála / Sabáliek

*"... la casería rústica titulada Ugarte zavala... situada en la barriada de Ocango jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende tres mil quinientos ochenta y cuatro pies cuadrados de planta solar, y la que se compone de una habitacion en su piso llano con sus correspondientes cuadras y divisiones, siendo su construcción de paredes de cal y canto..." DJE 1/168 (1865)*



*43° 10' 6"* *2° 33' 48"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Baserri honen gainean aurkitu dugun lehen arrasto dokumentala 1767koa da, *Ugarte Zabala* (BAHP, A765/32. or.) eta dokumentazioan beti izen bera mantendu da urteak aurrera egin ahala: *Ugárte-Zabála* (1859, BUA, Nmcr) eta *Ugartezabala* (1967, BUA, CE). Berriztarren artean, *Sabáliek* ere erabiltzen da gertu dauden hiru etxe horiek aipatzeko, eta *Sabála* erabiltzen da, aldiz, baserri hau identifikatzeko.

XIX. mendeko baserri-etxe handia, sasoiko modan jasoa. Goialdean izan zuen altxatze baten ondorioz simetrikotasuna galdu zuen, ardatza aldatu ziotelako. Beheko eta lehenengo solairua atarteko arku dotorearen arabera antolatuta daude. Behekoan, alboetan bina leiho daude; lehenengoan, gainean leiho luzea dauka, inskripzioduna, eta alde bakoitzean, beste hiruna leiho. Bigarren pisuan, ordenamendu hori aldatu egiten da, nahiz eta hor ere simetrikoa dirudien, teilatuaren gailurraren arabera ordenatu dutelako.

Porlanezko balkoi luzea dauka (1970ean jatorrian zurezkoa zen balkoia berriztu egin zen), bertara bi leiho luze zabaltzen direlarik, eta aldeetan, beste leiho bana. Hormak margotuta dauzka, kontrastea eginez leihoen, arkuaren eta etxe kantalen harlanduekin, baita beheko solairuko bistara atera dioten harlangaitzarekin ere (berritze-lan horiek 1990. urtean egin ziren). Bi isurkiko teilatua dauka. Arku gaineko leiho luzearen ateburuko inskripzioak nork eta noiz berreraiki zuen jakinarazten du: *"UGARTE [gurutzea] ZABALA / REEDIFICADA POR DA MARIA / MARTINA BESOITAGOENA / EN EL AÑO DE 1892"*.

toponimia

Uharte *hitz arrunta da euskaraz. Lehen "erreka bien artekoa" adierazten zuen eta orain itsasokoak ere adierazteko erabiltzen da. Izenaren osagaiak* ur *eta* arte *dira eta euskalki askotan* Uharte *bihurtu zen. Bigarren osagaia,* zabal*, argia da eta ez du aparteko azalpenik behar. Beraz* uharte etxe zabala *esango genuke beste txikiago baten kontrakoa.*





# Uribetxenagusia (-a)

etxebizitza

Aldaerak: Uribe Palazioa
Ahozkoa: Kátxarrona / Uríbe / Tabérnie



43° 9' 59"  2° 33' 30"  *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*"... la casería rústica titulada Echenausia o principal de Uribe... radicante en jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz,... comprende todo lo que ocupa el edificio y antusanos noventa y ocho estados poco más o menos, equivalentes a trescientos setenta y dos metros setecientos noventa y dos milímetros de cabida, y la que se compone de sus correspondientes pisos, cuadras, divisiones y habitaciones..." DJE 2/248 or. (1870)*

Dokumentazioaren arabera, Uribe auzoko etxe nagusia dugu honako hau. Bizkaiko su-erroldetan, 1704. urtean *Uribe* erreferentzia jasotzen da. Hortik aurrera, hainbat dokumentutan izen bera aurkitzen dugu: *Uribe* (1754, BAHP, A453/32. or.), *Uribe* (1825, PE/1825) eta *Uribe* (1967, BUA, CE). Dena den, *Uribe mayor* (1865, DJE, 1/ 148. or.) eta *Urive Echenausia* (1905, BUA, 40. or.) moduko aipamenak ere jasotzen dira. 1859. urteko izendegian *Uríbes* agertzen da, zonalde horretan aurkitzen diren baserri guztiei erreferentzia eginez, tartean hemen dugun *Uribetxenagusia* eraikina ere badagoela, noski. XX. mende hasieran, *Urive Palacio* (1910, BUA, RU) moduan agertzen da Berrizko Udalerrolda batean. Auzotarren artean, eta oro har herrian, *Kátxarrona*, *Uríbe* eta *Tabérnie* formekin ere ezagutzen da etxe hau.

Oso baserri etxe handia da. Hiru bizitza ditu gaur egun eta zaharberritze sakona izan du. Leiho baten gainean 1709ko data badu ere, bere rococo estiloko armarriak hamarkada batzuk beranduago egin zitekeela diosku, eta bere neurri eskergak ere hori pentsarazten du. Argi dago baserriaren fatxada planteatu zenean, etxearen ardatza nabarmentzea izan zela irizpidea. Ez da guztiz simetrikoa, ezkerraldea zerbait zabalagoa delako, baina apenas igartzen da hori. Erdian atartera sartzeko arku paregabea dauka eta bere gainean, Uribetarren armarria eta bi leiho, albo banatan. Lerrokatuta, ganbaran, beste bi leihotxo. Eta izkinetara, leihoak beheko eta lehenengo solairuan (hauetan bi, balkoi bihurtuta azkeneko erreforman), eta ganbaran ere bai, baina txikiagoak. Bi isuritako teilatua dauka, miru buztana deritzanarekin atzealdean.

## toponimia

*Bizkaian ohikoa da etxe izenak oso luzeak izatea, luzeenak Euskal Herrian lehenengo osagaia auzo izena izaten delako. Sarritan auzo izenaren oinarria etxe baten izena da. Etxe bakarra egon zen eta bigarren bat eraikitzean zerbait bereizgarri gehitzen zioten berriari eta gehienetan zaharrari. Denboraren poderioz auzoa sortzen zen eta etxe guztiek zuten hasiera bera zuen izena. Ahoz, gehienetan bigarren zatia besterik ez da erabiltzen. Kasu honetan "Uribe auzoko etxe nagusia" da, izenak argi erakusten duen bezala (***Ikus Uribealdekoa***).*



# Uribealdekoa etxebizitza

Aldaerak: Uribetxezaharra / Uribearnaga
Ahozkoa: Urrífiñona / Etxésarra / Uríbe arnaga

*"... la casería rústica titulada Arnaga... radicante en jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz... comprende de lo que ocupa el edificio y antusanos noventa y cinco estados... equivalentes a trescientos sesenta y un metros trescientos ochenta milímetros de cabida, y la que se compone de sus correspondientes pisos, cuadras y divisiones y habitaciones..."*
*DJE 2/244 or. (1870)*



*43° 9' 58"* *2° 33' 30"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Beste kasu batzuetan ikusi ahal dugun moduan (**Ikus Abaitualdekoa, Otsaitaldekoa** eta **Zalditurrialdekoa**), hau ere *Uribetxenagusia* (**Ikus Uribetxenagusia**) baserriaren jatorrizko eraikin gehigarria edo arnaga dugu. XX. mendeko erreferentziek horrela jasotzen dute: *Urive Arnaga* (1905eko eta 1910eko erroldetan jasota) eta *Uribearnaga* 1967an. Berriztarren artean, *Urrífiñona*, *Etxésarra* edo *Uríbe arnaga* moduan ezagutzen da ere.

Baserri bihurtutako arnaga da eraikin hau. Hiru etxebizitza ditu bere baitan, eta horretarako beharrezkoak izan diren eraldaketak egin zizkioten pasatu berri den XX. mendean. Zeharo berrituta dago. Diotenez, ezkutatuta egurrezko egitura dauka lehenengo pisuan eta ganbaran, XVII. mendean asko hedatu zen estilokoa; baina orain ez da ezer antzematen, dena luzituta eta pintatua dagoelako. Bi isurkiko teilatuaren azpian oso fatxada sinplea ikusten da. Sarrerako atea alde batean dauka, eta harekin lerrokatuta, leihoak. Ganbaran, leiho bakarra dauka ardatzean. Guztiek daukate plaka bat pintatuta inguruan.

toponimia

*Mendebaldeko toponimo arrunta da Uribe, besteak beste merindade zahar baten izena. Uri hitzaren esanahia argia da "hiri", baina sarritan, izen zaharretan, kasu honetan bezala, ez da hiribildua edo populatutako auzoa, etxe soila baizik. Beraz badirudi "beheko etxea" esan nahi zuela izen honek. Hala eta guztiz ere, toponimian ageri den -be osagai hori "txiki" moduan ere itzuli izan da. Hori horrela balitz "etxetxu" izango litzateke esanahia. Aldeko hitzak ez du aparteko zailtasunik*

# Uribeganekoa (-a) etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: **Uríbegánekúe**



43° 10'3"    2° 33'27"    *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*"... la casería titulada Uribeganecoa... situada en la barriada de Ocango jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende ciento treinta y dos estados cuadrados superficiales de planta solar, y la que se compone de una vivienda con piso bajo y alto a manera de entresuelo, con su zaguan y accesoria..." DJE 1/148 or. (1865)*

Bizitza bakarreko baserri honen gaineko lehendabiziko erreferentzia 1796koa da, hots, *Uribeganecoa* (BAHP, A78/7), eta gerora izen horrekin mantendu da inongo aldaketarik gabe: *Uribeganecoa* (1825, PE/1825), *Urive Ganecua* (1905) BUA, 40. or.) eta *Uribeganecoa* (1967, BUA, CE). Auzotarren artean, *Uríbegánekúe* da formarik erabiliena. Egun, baserriak *BEACI* arrautza-ekoizleen enpresa hartzen du.

XIX. mendeko baserri etxea, goranzko tendentzia bistan duena, eta erdialdea indartzeko intentzioa ere bai. Bere eskema sinplea da. Beheko pisuko erdi-erdian atarte zabala dauka, arku eder batek babestua. Gaineko solairuan, balkoi txikia, lerrokatuta. Eta gorengoan, aldetik alde, balkoi luzea, biak burdinazko karelaz. Alboetako bi ardatzetan, leihoak, txikiagoak ganbarakoak izanik. Bi isuritako teilatua dauka, hormak guztiz enfoskatuta eta pintatuta daude, eta etxearen kantalak, arkua eta bao guztien ertzak harlanduaz indartuta. Inskripzio batek diosku nortzuek eta noiz berregin zuten etxea: *"RE-EDIFICADA PORDON / JUANUNZUETA Y DOÑA / MARIAURIBEGANECOA CON- / SORTESAÑO 1913"*

## toponimia

*Bizkaian ohikoa da etxe izenak oso luzeak izatea, luzeenak Euskal Herrian lehenengo osagaia auzo izena izaten delako. Sarritan auzo izenaren oinarria etxe baten izena da. Etxe bakarra egon zen eta bigarren bat eraikitzean zerbait bereizgarri gehitzen zioten berriari eta gehienetan zaharrari. Denboraren poderioz auzoa sortzen zen eta etxe guztiek zuten hasiera bera zuen izena. Ahoz, gehienetan bigarren zatia besterik ez da erabiltzen. Kasu honetan Uribe auzoan goiko aldean dagoen etxea da (***Ikus Uribealdekoa***).*



# Uribetxea (-a) etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Uríbetxa / Uríbitxa

*"... la casería rústica titulada Uribe echea... radicante en jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz... comprende noventa estados... equivalentes a trescientos cuarenta y dos metros trescientos sesenta milímetros de cabida, y la que se compone de sus correspondientes cuadras, divisiones y habitaciones..."*
*DJE 2/235 or. (1870)*



*43° 10' 4"* *2° 33' 26"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Uribe auzunean kokatzen den baserri honen gaineko aipamenak goiztiarrak dira, eta, hala, Bizkaiko su-erroldetan *Uribe Echea* (1704) eta *Vribe Echea* (1745) agertzen zaizkigu. Idatzizko forman ia aldaketarik ez du jasan, eta modu berean dokumentatua izan da azken mendeetan: *Uribeche* (1825, PE/1825), *Uribe-echéa* (1859, BUA, Nmcr), *Urive Echea* (1905) BUA, 40. or.) edota *Uribechea* 1967ko Udal-erroldan. Ahozko transmisioan *Uríbetxa* edo *Uríbitxa* dira berriztarrek erabilitako erak.

XVIII. mendeko eraikuntza apala da, gaur egungo berriztatzearen ondoren, zeharo dotoretu badute ere. Harlangaitzak eta baoetako egurrezko dintelek hala adierazten dute. Fatxadaren antolamendua argia da. Baoak hiru ardatzen arabera egituratuta daude, nahiz eta beheko solairuan antolaketa hori ez bete, atea aldamen batean dagoelako, simetria ardatzetik eskumatara. Bi isurkiko teilatua eta bi pisu ditu, baita ganbara ere, frontaleko leiho bakarrak erakusten duen legez.

toponimia

*Bizkaian ohikoa da etxe izenak oso luzeak izatea, luzeenak Euskal Herrian lehenengo osagaia auzo izena izaten delako. Sarritan auzo izenaren oinarria etxe baten izena da. Etxe bakarra egon zen eta bigarren bat eraikitzean zerbait bereizgarri gehitzen zioten berriari eta gehienetan zaharrari. Denboraren poderioz auzoa sortzen zen eta etxe guztiek zuten hasiera bera zuen izena. Ahoz, gehienetan bigarren zatia besterik ez da erabiltzen. Kasu honetan* Uribe *izeneko etxea da, izenak argi erakusten duen bezala.*





# Uribetxebarria (-a) etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Uríbetxébarria



43° 10' 4" 2° 33' 26" *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*Uribetxea* (**Ikus Uribetxea**) baserriaren ondoan XX. mende erdialdera eraikitako etxe berria dugu honako hau. Bi eraikinak bata bestearen ondoan eraikita daude, eta horren ondorioz, biak *Uribetxea* moduan ezagutzen dira, bigarren hau *Uribetxebarria* dela bereizi barik. Auzotarren artean, *Uríbetxébarria* moduan ezagutzen da.

XX. mendeko etxea, luze eta estua. Garai hartan egiten ziren eran jasota dago. Bi isuritako teilatuaren azpian etxe soila ageri da. Fatxadak luzituta dauzka, osteko sotano aldea ezik, harrizkoa baita. Ertzak, berriz, plaka fin bat margotuta indartu dira. Sarritan gertatu legez, sarrerako eskailerak albo batean atxikita ditu, kanpoan, azpialde guztia soto eran aprobetxatuta dagoelako. Fatxada nagusia *Uribetxeko* larrainera ematen duena da, eta teilatuaren gailurraren paraleloa da. Baoen ordena sinplea da: solairu nagusian, lau leiho eta lerrokatuta, ganbaran, beste lau baina txikitxoak. Alderik estuenean, izkinan dagoen etxeko atearen ondoan, beste leiho bat. Eta ganbaran, bi leiho etzan.

## toponimia

*Deitura moduan oso ezaguna den etxe izen honen osagaiak* uri, *euskara batuan 'hiri', baina kasu honetan etxe esangurarekin,* etxe *hitz arrunta,* barri *adjektiboa eta artikulua dira: Uribe auzoko etxe berria. Deigarri da Uribetxebarria deitura Donostialdera joatean Uribetxeberria bihurtzea eskribauek* berri *egokiago ikusten baitzuten. Baina bizkaierazko deitura honek* uri *eta* barri *ditu, ez* berri *ez* hiri.

# Urretxandikoa (-a) etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Urrétxandíkue / Urritxandikue



43° 10' 9" 2° 33' 57" *Berriz Irudita / J.A. Ramos*

Okango kofradiaren baitan aurkitzen dugun baserri-etxe handia dugu honako hau, XVIII. mendetik dokumentatzen dena, *Urrecha* edo *Urrecha de Suso* aipamenak aurkitzen ditugu 1704. urteko Bizkaiko su-erroldetan. Maiz gertatzen den bezala, hemen ere *Urretxa* izeneko baserri bi aurkitzen ditugu jatorrian, eta hortik datoz bereizteko erabiltzen diren forma desberdinak, besteak beste: *Urrecha de Yuso* (1796, Bizkaiko su-erroldak), *Urrecha andicoa* eta *Urrecha* (1825, PE), *Urrechabeascoa* (1845, BAHP, A32/37. or.) edo *Urrechaganecua* (1870, DJE, 2/ 235. or.).

1859ko izendegian *Urréchas* (BUA) era agertzen da, leku honetan dauden baserri biei erreferentzia egiteko. XX. mendean sartuta, eta batez ere azken urteetan, *Urricha Andicua* (1905, BUA, 40. or.), *Urrecha andicoa* (1910, BUA, RU) eta *Urrechandicoa* (1967, BUA, CE) formak nagusitu dira. Bilbo-

*"... la casería titulada 'Urrecha' situada en el barrio de Ocango, de la anteiglesia de Berriz... se compone de piso bajo y alto, y es de una vivienda, comprende con su horno y zaguan ciento veinte y un estados, equivalentes a cuatrocientos cincuenta y siete metros..."*
*DJE 6/136 or. (1892)*

*"... la mitad de la casería rústica titulada Urrecha-andicoa... situada en jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende cincuenta y dos y medio estados cuadrados superficiales de planta solar, y la que se compone de sus correspondientes pisos, cuadras y habitaciones..."*
*DJE 1/215 or. (1866)*

toponimia

*Toponimian oso arruntak dira zuhaitz izenak kasu honetan bezala. Gaur egun urritxa ez da oso preziatua eta gehienbat Turkiatik ekartzen da fruitua, baina garaia batean zuhaitz xume honek ematen zuen fruitua oso preziatua zen zaporeagatik eta gordetzeko erraztasunarengatik. Gainera bere makilak erabiltzen ziren saskigintzan, etxe barruko ormak eraikitzeko, aulkietan eta arrantzarako tresnetan. Izenaren bigarren osagaiak,* -andikoa*, Urretxa etxeen artean, "beste aldean" dagoen etxea adierazi nahi du.*






*Berriz Irudítan / T. Angoitia*

Baiona autopista egiterakoan, *Urretxa* edo *Urretxazarra* baserria desagertu zen, eta hortik datorkio jatorrizko baserriaren ondoan egindako eraikin batek hartu duen *Urretxazarra* izena (**Ikus Urretxazarra**). Berriztarren artean, *Urrétxandíkue* edo *Urritxandikue* moduan ezaguna da baserri hau, eta zonalde berean egin diren beste eraikin berrientzako erreferente izan da, esaterako: *Urretxagana* (**Ikus Urretxagana**) eta *Urretxaburu* (**Ikus Urretxaburu**).

Baserri etxe handiak, XIX. mendeko eta XX. mende hasierako taxuketa gordetzen du. Harreman estua dauka *Gangutia* (**Ikus Gangutia**) eta *Zelaietarekin* (**Ikus Zelaieta**), nahiz eta 1974an berreraiki egin zuten, inskripzio batek argitu moduan. Hiru solairu eta ganbara ditu. Harlangaitzaz jaso zuten eta harlandua erabili zuten baoak burutzeko, atarteko sarrerako arku eder biak eta etxe kantaletarako. Baoetan, nabarmenak dira arkuen gaineko balkoiak, lehenengo pisukoa, txikia; eta bigarrenekoa, ostera, alderik aldekoa. Ia arau zena sasoi hartan, bi isuritako teilatua du. Berreraikitze eta dataren inguruko informazioa sarrerako arkuen arteko inskripzioak diosku: *"REEDIFICADO / BE AYARZAGUENA / CA OREGUI / CONSORTES / MO AZPITARTE / MA TA ARGOITIA / CONSORTES / AÑO-1974 / URRECHA"*.





# Urretxazarra (-a) etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Urritxezarra



43° 10' 8" 2° 34' 9" *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Arestian aipatu dugun moduan (**Ikus Urretxandikoa**), *Urretxa* izeneko baserrien ondoan XX. mendearen erdialdean jasotako eraikina dugu honako hau. 1970eko hamarkada hasieran Berriztik pasatzen den autopista egiterakoan, *Urretxa* edo *Urretxazarra* baserria desagertu zen, eta hortik dator eraikin honek hartu duen izena.

Etxe soila eta apala da, inposta-marrak bereizitako bi solairutan eratutakoa. Leihoak, neurri onekoak diren arren, urriak dira. Hormak luzituta eta pintatuta dauzka. Soiltasuna soiltasun, baditu ezaugarri bi kalitatezko etxeenak izaten zirenak, hau da, aipatutako inposta-marra eta lau isuritako teilatua.

toponimia

*Izenaren lehen osagaiaren inguruan aipatutakoaz aparte (***Ikus Urretxandikoa***), kasu honetan bigarren osagaiak,* -zaharra, Urretxa *izeneko etxe guztien artean lehena dela adierazten digu.*



# Urretxaburu

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa:



43° 10' 14" 2° 33' 60" Berriz Iruditan / J.A. Ramos

XX. mende amaieran eraikitako txaleta dugu honako hau, *Urretxa* baserrien (**Ikus Urretxandikoa** eta **Urretxazarra**) inguruan. Jatorrizko baserri horiek erreferente izanik eta kokapenari erreparatuz, *Urretxaburu* izena hartu du.

Etxe luzanga da, isurki biko teilatuduna. Ondoan badu erantsita beste eraikin txikiago bat, hori ere teilatu eta guzti. Bi pisutako txaleta da, eta fatxada nagusian alde bi bereiz daitezke. Batean, ezkerraldean, leiho baten ondoan sarrerako arku ederra dugu, eta gainean, balkoia. Eskuman, ostera, leihoak dira nagusi, goian eta behean. Hormak luzituta eta zurituta dauzka eta, kontrastea areagotzeko, egurra erabili zuten teilatuaren egituran, pertsianetan eta balkoiaren karelean.

toponimia

*Izenaren lehen osagaiaren inguruan aipatutakoaz aparte (***Ikus Urretxandikoa***), kasu honetan izenaren bigarren osagaia,* -buru*, oso arrunta da toponimian nahiz eta gero* -gain *hitzak ordezkatu zuen.*





# Urretxagana etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa:



43° 10' 12" 2° 34' 0" Berriz Iruditan / J.A. Ramos

*Urretxaburu* txaletarekin batera, zonalde berean eta garai berean eraikitako beste txalet bat dugu honako hau. Eraikin berriekin gertatzen den moduan, kokapenari erreparatuta *Urretxagana* izena hartu du eraikin honek.

Txalet modernoa dugu, sartu-irten joko berezian fatxada eratuta daukana. Bi pisu baino ez ditu, eta biak simetria ardatz zorrotzaren arabera antolatu dira. Horrela, beheko pisuko aldamenetan leiho bana dago, eta barrurago sartuta, hexagono baten erdian, sarrerako atea. Goian, berriz, alboetan balkoiak dauzka eta erdian irtenda, begiratokia, beste hexagono erdi batean eutsita.

toponimia

*Izenaren lehen osagaiaren inguruan aipatutakoaz aparte (***Ikus Urretxandikoa***), kasu honetan izenaren bigarren osagaia,* -gana*, oso arrunta da toponimian eta* buru-ren *kidea da esanguraz.*



# Urtiaga

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Urtía

*"... la casería rústica titulada Urtiaga... situada en la barriada de Ocango jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende con inclusión de su horno tres mil seiscientos cincuenta y nueve pies cuadrados superficiales de planta solar, y la que se compone de piso bajo con zaguan, cocina, horno, cuarto dormitorio y cuadra, y piso principal con sala, una cuarto, pajar y camarote..."*
*DJE 2/58 or. (1866)*



*43° 10' 16"* *2° 33' 47"* *Berriz Irudita n / J.A. Ramos*

Topatutako lehen arrasto dokumentala 1704koa da, hots, *Urteaga* (1704, Bizkaiko su-erroldak), eta bertan Okango kofradiaren baitan agertzen den baserri bati erreferentzia egiteko erabiltzen da izen hau. Hortik aurrera, errolda guztietan behin eta berriz agertzen da baserria. Ahozko formaren eraginez, XIX. mendeko bigarren erdian eta batez ere XX. mendean zehar, *Urtiaga* (1905, BUA, 40. or.) eta *Urtiaga* (1967, BUA, CE) idatzizko era nagusitzen da. Inguruan, *Urtiagazelaia* (**Ikus Urtiagazelaia**) eta *Urtiagaetxebarria* (**Ikus Urtiagaetxebarria**) baserriak daude, eta horregatik 1859ko udal-izendegian *Urtiágas* moduan agertzen dira, hiru baserri hauei erreferentzia eginez. Auzotarren artean, *Urtía* da formarik erabiliena.

Baserri etxe ederra, hiru bizitzakoa. Guztiz berriztu dute XX. mende amaieran eta fatxada nagusia bitan bananduta ageri da, irizpide desberdinak jarraitu dituztelako hormen eta baoen tratamenduan. Hala ere, oraindik antzeman daiteke atarte zabaleko dinteldun etxea zela, zutikoa edo mogarak eutsia, aprobetxatu duten erdibitzeko. Bestetik, ohiko leihoak ditu beheko zein lehenengo solairuan, baita ganbaran ere. Bi isuritako teilatua dauka.

toponimia

*K. Mitxelenaren ustez urte "avenida" hitza dago izen honen jatorrian eta tokia adierazten duen -aga atzizkia.*

# Urtiagaetxebarria (-a) etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Urtétxébarri



43° 10' 21" 2° 33' 37" *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*"... la casería rústica titulada Urtiaga Echevarria y sus pertenecidos radicantes en jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz... radicante en el barrio de Ocango... es de una vivienda y consta de piso llano, alto o principal y desban; ocupa una planta solar de ciento treinta metros incluso la que ocupa su horno contiguo..."*
*DJE 4/94 or. (1878)*

*Urtiaga* (**Ikus Urtiaga**) baserriaren goialdean, *Armotxa* (**Ikus Armotxa**) baserrira doan bidearen ondoan kokatuta zegoen. Jatorrizko baserriaren lehendabiziko aipamena Bizkaiko su-erroldetan aurkitzen dugu 1704. urtean, hots, *Urteaga Echauarria*. Mendeetako dokumentazioan aldaera gutxi ezagutu ditu izen honek, eta *Urtiagaechevarria* (1857, BUA, Viv) eta *Urtiaga-echevarria* (1878, DJE, 4/ 94. or.) dira horren adibide. XX. mende hasieran ahozko formaren eraginez, *Urtia Echevarria* (1905, BUA, 40. or.) topatzen dugu, nahiz eta orokorrean jatorrizko era mantentzen den, 1967ko eraikinen erroldan ageri den moduan *Urtiagaechevarri* (1967, BUA, CE). Auzotarren artean, *Urtétxébarri* da ahozko formarik erabiliena.

XX. mendeko 80. hamarkadan jausitako baserriaren ordez jasotako etxe berria, txalet erakoa. Oso modu sinplean antolatuta dauka bere fatxada nagusia eta, neurri batean behintzat, saiatu dira tradizio gaurkotuan oinarritzen. Hala, atartea dintelduna da eta leihoak ditu beheko zein lehenengo solairuan, denak hormigoizko plakez inguratuta, pisu horietako harrizko hormekin kontrastea eginez. Inposta marra batek bereizten ditu solairuak, baita ganbara ere. Hango horma luzituta eta pintatua dago. Bi isuritako teilatua dauka.

## toponimia

*Bizkaian ohikoa da etxe izenak oso luzeak izatea, luzeenak Euskal Herrian lehenengo osagaia auzo izena izaten delako. Sarritan auzo izenaren oinarria etxe baten izena da. Etxe bakarra egon zen eta bigarren bat eraikitzean zerbait bereizgarri gehitzen zioten berriari eta gehienetan zaharrari. Denboraren podherioz auzoa sortzen zen eta etxe guztiek zuten hasiera bera zuen izena. Ahoz, gehienetan bigarren zatia besterik ez da erabiltzen. Kasu honetan* Urtiaga *auzoko etxe berria da.*



# Urtiagazelaia

desagertuta

Aldaerak:
Ahozkoa:

*"... la casería nombrada Urtiaga-celaya,... [hoy derruida existiendo solo el solar de la misma] radicante en el barrio de Ocango de Berriz, que constaba de una vivienda, piso bajo y alto y camarote señalada con el numero cien, mide ochocientos sesenta y ocho estados treinta y tres áreas, dos centiáreas, confinando por Oriente con heredades de la casería de Aránsolo, y por Mediodía, Poniente y Norte con terrenos de la casería de Urtiaga, con inclusión de una heredad, huerta y horno..."*
*DJE 4/15. or. (1878)*


Se halla valuada esta finca en doce
pesetas
6 La casería nombrada Urtiaga-celaya
derruida existiendo solo el solar de la
ma radicante en el barrio de Ocango
Berriz que constaba de una vivienda
bajo y alto y camarote señalada con el
mero cien, mide ochocientos sesenta y
estados treinta y tres areas dos centiar
confinando por Oriente con heredades

*Berriz Irudiтan / J.A. Ramos*

Bizkaiko su-erroldetan baserri honen berri aurkitzen dugu 1745. urtean, hots, *Vrteaga Zelaya*. Gerora, 1825eko polizia-erroldan ere agertzen zaigu (*Urteacelaya*), baina hortik aurrera ez dugu inongo arrastorik. Arginzoniz familiaren baserria zen, eta Juan Jose Arguinzonizek (*Olabebengoetxea*) dioenaren arabera, haren aitiaren eskrituretan "*desagertuta*" moduan agertzen da. Hark azaldutakoaren arabera, *Urtiaga* baserriaren goialdean zegoen kokatuta, gutxi gorabehera egun txalet berria dagoen inguru horretan.

toponimia

*Bizkaian ohikoa da etxe izenak oso luzeak izatea, luzeenak Euskal Herrian lehenengo osagaia auzo izena izaten delako. Sarritan auzo izenaren oinarria etxe baten izena da. Etxe bakarra egon zen eta bigarren bat eraikitzean zerbait bereizgarri gehitzen zioten berriari eta gehienetan zaharrari. Denboraren poderioz auzoa sortzen zen eta etxe guztiek zuten hasiera bera zuen izena. Ahoz, gehienetan bigarren zatia besterik ez da erabiltzen. Kasu honetan* Urtiaga *auzoko inguru zelai edo lauan eraikitako etxea da.*



# Usabel desagertuta

Aldaerak:
Ahozkoa: Usábel




*BUA / Mapa topografikoa, 1933*

*"... la casería rústica titulada Usabel... situada en la barriada de Ocango jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende con inclusión de su horno dos mil ciento setenta y nueve pies cuadrados superficiales de planta solar, y la que se compone de piso bajo con zaguan cuadra y un cuarto, y de piso principal con cocina, tres cuartos y pajar, y de otro piso con camarote, confinante por sudeste con el medianil comun de la casa de Maisujuan, por sur con camino publico que dirige desde Olacueta a Zaldua, por oeste con un entrecalle o bacio que resulta entre la casa quemada perteneciente a Dn Francisco de Urrecha, y propia pared del alzado de la casa, y por norte con huerta de la propia caseria..."*
*DJE 2/54 or. (1867)*

Berrizko *Ospitale* (**Ikus Ospitale**) ondoan kokatzen zen baserria zen honako hau, egun desagertuta dagoena. XVIII. mendeko Bizkaiko su-erroldetan dugu honen berri, *Usabel* (1704 eta 1796) edo *Vsabel* (1745) aipuak agertzen direlarik. Hortik aurrera, XIX. eta XX. mendeetan mantenduko den era izango da honako hau, aldaera gutxirekin, eta *Usabel* (1825, PE/1825), *Uzabel* (1905, BUA, 40. or.) eta *Usabelena* (1967, BUA, CE) dira horren adibide. Egun, herritarren artean ezezaguna izan arren, baserri horrekin oroitzen direnak *Usábel* forma erabiltzen dute.

toponimia

*Harrigarria bada ere izen honen osagarriak* ur *hitza, izen konposatu zaharrenetan* u- *bihurtzen dena eta toponimian arrunta den* sabel *hitza. Gogoan izan* ur *hitza gehienetan* erreka *esanguraren erabiltzen zela. Oso arrunta da leku izenetan gorputzaren zatiak agertzea, batez ere* buru, *baina horrekin batera baditugu* bizkar *edo* sabel.



# Zabala (-a) etxebizitza

Aldaerak: Zabale
Ahozkoa: Sabála / Sabáliek

*"... la casería rústica titulada Zavala emeticoa... situada en la barriada de Ocango jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende con su zaguan ciento cuarenta y cuatro estados cuadrados superficiales de planta solar, y la que se compone de una vivienda con piso bajo y alto..."*
*DJE 1/144 or. (1865)*



*43° 10' 6"* *2° 33' 42"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Topatutako lehen arrasto dokumentala 1704koa da: Bizkaiko su-erroldetan *Zabala de Yuso* izeneko baserria agertzen da Okango kofradiaren baitan. Hortik aurrera, izen desberdinekin agertzen zaigu dokumentazioan, hala nola *Zavala* (1826, BAHP, A381/15), *Zavala emeticoa* (1852, BAHP, A488/37) eta *Zabalaemeticoa* (1967, BUA, CE).

1859ko izendegian *Zabálas* aipua agertzen zaigu, horren inguruan dauden hiru etxeei erreferentzia egiteko. Ahozko formetan ere, *Sabáliek* erabiltzen da hiru etxeei erreferentzia egiteko, eta *Sabála* izenaz identifikatzen da behealdean dagoen baserria; goialdekoa, berriz, *Zabalandikoa* moduan ezagutzen da (**Ikus Zabalandikoa**).

Baserri ederra, 1800 inguruan eta beranduago ere egiten zirenen ezaugarriak dituena, XX. mendean erreforma sakona jasan arren. Bi isuritako teilatuaren azpian etxe ordenatua antzematen da. Ardatz lana egiten dute, eta arreta erakarri ere, atarteko arku ederrak eta bere gaineko balkoiek (hormigoizko zorua dutenak), txikiagoa, lehenengo solairukoa, eta zabalagoa, ganbarakoa. Hortik aldamenetara, bina leiho pisu bakoitzean. Beheko solairuan gaur egun hormetako harlangaitza bistan dago, nahiz eta arkua eta leihoak harlanduzkoak izan. Gainekoetan, inposta marra batek desberdinduta, hormak guztiz luzituta eta baoen ertz guztiak porlanezko plaka batek atonduta ageri dira, azkeneko erreformaren adierazgarri.

toponimia

*Aparteko azalpenik behar ez duen hitza. Ahoz arrunta da Sabale esatea, eta hori dela inoiz* Zabale *moduan ere idatzi izan da.*



# Zabalandikoa (-a) etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Sabalándikúe / Sabáliek



43° 10' 5" 2° 33' 40" Berriz Irudítan / J.A. Ramos

*"... la casería titulada Zavala-andicoa... situada en la barriada de Ocango jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende con inclusion de un horno, zaguanes y tejabana doscientos veinte y siete estados cuadrados superficiales de planta solar y la que se compone de dos viviendas con piso bajo y alto a manera de entresuelo..."*
*DJE 1/152 or. (1865)*

Egun Bilbo-Baiona autopistaren ondoan kokatzen den baserri honen gaineko lehen aipamena XVIII. mendeko Bizkaiko su-erroldetan aurkitzen dugu, 1704. urtean *Zabala de Suso* moduan agertzen baita. Horrek agerian uzten du beheko partean *Zabala de Yuso* izeneko beste baserri bat zegoela (**Ikus Zabala**). 1825eko polizia-erroldan *Zabala de alla* agertzen den bitartean, hurrengo urtean, 1826an, *Zabalaandicoa* (1826, BAHP, A331/15. or.) euskal forma erregistratzen da lehendabizikoz.

1859ko salbuespenarekin, izendegian *Zabálas* izenarekin inguruan dauden hiru etxeei erreferentzia egiten zaie, eta *Zavala andicoa* (1865, DJE, 1/ 148. or.) idatzizko forma gailentzen da XIX. mendeko bigarren erdialdetik aurrera: *Zavala Andicua* (1905, BUA, 40. or.) eta *Zabalaandicoa* (1967, BUA, CE). Berriztarren artean ere, *Sabáliek* izendapenaz erreferentzia egiten zaie hiru etxe hauei, eta *Sabalándikúe* erabiltzen da goialdean dagoen baserria identifikatzeko.

toponimia

*Izenaren bigarren osagaiak,* Andikoa, *Zabala etxearen "beste aldean" dagoen etxea adierazi nahi du eta ez* handia.





*Berriz Iruditan / T. Angoitia*

XIX. mendeko eta XX. mende hasierako baserri tipikoa, bi pisu eta ganbaraduna. Hormak luzitu eta pintaturik baditu ere, aipatzekoak dira harlanduzko leiho ederrak eta atarteko arkuak ere, edo ganbarako balkoia, hormigoizko zorua daukana eta burdinazko karela. Teilatua bi isurkitakoa da. Hala ere, esan beharra dago jatorrizko etxea txikiagoa zela, eta fatxada nagusia simetrikoa izango zela, sarrerako arkuak ardatz hartuta. Arku bat oraintsu atera dute, etxea eraberritu dutenean. Beste ekinaldi batean handitu egin zuten, eskuma aldera beste bina leiho zabalduz pisu bakoitzean. Segurutik, orduan aldatuko zuten etxearen gailurra eta ganbara ere garai berean burutuko zuten, gaur egun duen itxura ordenatua emanaz.

# Sallobente - Mendibil

Abaitua
Abaitualdekoa
Abaitubidekurutzeta
Abaituburu
Abaituetxebarria
Abaituerrota
Abaituiturriondo
Abaituola
Abeletxe
Agirresakona
Apaizetxea
Aretxaga
Aretxandieta
Arkotxa
Arrieta
Arriortua
Arriortuabarria
Batarrita
Batarritaetxebarria
Bentatxu
Berriz
Besoitabeitia
Besoitagoena
Besoitaetxebarria
Besoitaiturria
Besoitaormaetxea
Besoitaorue
Betzuen
Bidazpia
Bidebarrieta
Bixona
Bizkargan
Deskarga
Done Joanes Ebanjelaria
Done Laurendi
Elexaoste
Elizgain
Erdikoetxea
Errementaria
Etxaburu
Etxaburuaurrekoa
Etxezuria
Fonda
Foralena
Ganekoetxea
Ganekoetxetxikia
Iturritzaga
Kotxera
Lariz
Larizerdikoa
Larizgoitia
Larizkoerrota
Larizondo
Lasuen
Lasuenandikoa
Lasuengana
Legorreta
Lupita
Mendibarrena
Mertzedariak
Mesedetako Ama
Okagoikoa
Okabekoa
Olakua
Pozaena
San Kristobal Txiki
Txirriena
Udaletxezarra
Ugaldea
Ugalderrota

# Abaitua (-a) etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Abáittu



43° 10' 56"     2° 34' 30"     Berriz Iruditan / J.A. Ramos

*"... la casa principal rústica de Abaitua, sus accesorias y pertenecidos radicantes en jurisdicción de la anteiglesia de Berriz... sita en la barriada de San Lorenzo... es de una vivienda y consta de piso llano, alto y desban o camarote, ocupa una planta solar de trescientos veinte y siete metros cuadrados incluso lo que ocupan su horno y dos tejabanas contiguas..."*
*DJE 4/86 or. (1878)*

*Abaitua* baserria izan zen hasierako etxea eta geroago, beste hiru eraiki ziren: *Abaituetxebarria*, *Abaitubidekurutzeta* eta *Abaituola*. Baserri honen gaineko lehen aipuak XVIII. mende hasieran aurkitzen dugu *Abaytua* (1704) Bizkaiko lehen su-erroldan. Hortik aurrera, forma bera aurkitzen dugu dokumentu guztietan, ia aldaketarik gabe; *Abaittua* (1797, BAHP, A67/8), *Abáitua* (1859, BUA, Nmcr) eta *Abaitua* (1967) mende amaierako erroldan. *San Lorentzo* aldean dugun baserria *Abáittu* moduan ezagutzen da berriztarren artean.

Baserri-etxe handia dugu, pisu bi eta ganbara dituena. Isurki biko teilatuaren azpian oso etxe ordenatua eta simetrikoa ikusten da: atarte gisa bi arku eder dauzka erdian, egitura antolatzen dutenak. Gainean, balkoi txiki bana dauka, harrizko zoruarekin eta burdinazko karelekin, eta ganbaran, berriz, alderik alde doan egurrezko balkoia, bertara beste bi leiho luze zabaltzen direlarik, behekoekin lerrokatuta. Aldamenetan ere, leihoak ditu, baita ganbara aldean ere, hori bai, txikiagoak.

Etxea harlangaitzaz jaso zuten, eta ziurrenik jatorrian estalita egongo zen, oinarrietako alde batzuk eta bao guztiak izan ezik. Azken horietan harlandu ederra erabili zen arkuetan, leihoetan zein kantaletan. Oinarrian XVI. mendeko silarria tipikoa dauka, baita ezkerraldeko leiho hegian dagoen molduran ere. Gainekoa, aldiz, XIX. mendean egindako berreraikitzearen ondorio da. Lehenengo pisuko balkoien artean inskripzio bat dugu: "*SE REEDIFICO POR JUAN / VICENTE MARQUINA Y SU / HIJO JUAN LEON AÑO DE / 1878*". Azken berritze-lanak 1980ko hamarkadakoak dira.

toponimia

*Nahiz eta aurkitu dugun aipurik zaharrena 1704koa izan,* Abaytua*, badakigu baserria zaharragoa dela eta gutxienez XVI. mendean bazegoela deitura eman baitigu. Honek, hala ere, ez du esan nahi egungo eraikuntza XVI. mendekoa dela, baserriak berreraiki baitira etengabe, erretzen zirenean edo besterik gabe zaharkituta zeudenean. Esanahia iluna da, bigarren osagaiak (*-tu*) aditz bat dela adierazten digu, baina ez dakigu besterik.*



# Abaitualdekoa

etxebizitza

Aldaerak: Abaituarnaga
Ahozkoa: Árna

*"... la casa de Abaitu-arnaga radicante en dicho barrio de San Lorenzo... es de una vivienda y consta de piso llano, alto y desban o camarote, ocupa una planta solar de doscientos sesenta y dos metros incluso lo que ocupa su horno y tejabanas..." DJE 4/86 or. (1878)*



*43° 10' 56" 2° 34' 28" Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*Abaitua* (**Ikus Abaitua**) baserriari lotuta agertzen zaigu eraikin hau. 1825eko polizia-erroldan *Arnaga de Abaitua* izena aurkitzen dugu, eta horrela jasoko da dokumentazioan XX. mendera arte: *Abáitua-Árnaga* (1859ko izendegia), *Abaitua-arnaga* (1878, DJE, 4/ 86. or.) eta *Abaitua arnaga* (1967, BUA, CE), berriz, azken erroldan. Auzotarren artean, *Árna* moduan ezagutzen da. Dena den, ikerketa toponimikoaren harira, *arnaga* eta *akzesoria* moduan agertzen diren eraikin guztiak -*aldekoa* izen-osagaiaren bidez identifikatzea erabaki da, eta hortik datorkigu *Abaitualdekoa*.

Etxe bihurtutako arnaga da, eta oraindik kontserbatzen ditu eraikin originalaren kanpoko eskailerak eta leiho eta ateen ertzetako jatorrizko harlanduak ere. Bi isurkiko teilatuaren babesean etxe sinplea ikus daiteke, bi pisurekin eta ganbararekin. Sarrerako ateak ditu fatxada estu bien erdian, eta alboetan, berriz, leihoak dauzka, arnagaren eskailerak zeuden aldean izan ezik. Azken horretan goiko atea balkoi bihurtu dute, eta zoruak aterpe funtzioa ere betetzen du. Harlangaitzezko hormak ditu, eta harlandua dauka ohiko lekuetan, batik bat XX. mende amaieran eraberritu zutenean irekitako leiho berrietan. Eraikina zaharragoa da, arnagako ateburuko inskripzioak argi uzten duen moduan: "*ANO DE 1696*".

toponimia

*Bizkaian ohikoa da etxe izenak oso luzeak izatea, luzeenak Euskal Herrian, lehenengo osagaia auzoaren izena izaten delako. Sarritan auzo izena hasieran etxe baten izena zen. Etxe bakarra egon zen eta bigarren bat eraikitzean zerbait bereizgarri gehitu zioten berriari eta gehienetan zaharrari. Denboraren poderioz auzoa sortu zen eta etxe guztiek zuten hasiera bera dute izenean. Hori bai, ahoz gehienetan bigarren zatia besterik ez da erabiltzen. Kasu honetan* alde *hitza dugu Abaitu zaharraren ondokoa dela adierazteko. Durangaldean hitz hau "auzo" moduan erabilia izan da eta* Aldegoiena *dugu, esaterako, Mañarian.*

# Abaitubidekurutzeta etxebizitza

Aldaerak: Bidekurutzeta / Karterukua
Karteruena
Ahozkoa: Kartéruana / Kartérukúa



*43° 10' 54"* *2° 34' 28"* *Berriz Irudian / J.A. Ramos*

*"... la casa posada titulada Videcuruceta... situada en el barrio de San Lorentzo jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende con inclusión de los terrenos de su contigüedad setenta y tres y medio estados cuadrados superficiales de área, y la que se compone de sus correspondientes cuadras y habitaciones..."*
*DJE 1/177 or. (1865)*

Gaur egun taberna eta egun landetxea den baserri hau Berriztarren artean *Kartéruana* edo *Kartérukúa* moduan ezagutzen da. Honen gaineko lehendabiziko aipuak XVIII. eta XIX. mendeetan agertzen dira: *Abáitu-Videcrucéta* (1859, BUA, Nmcr). Beranduago, Puerto Ricoko apezpiku izandako Juan Bautista de Zengotita Vengoa jaio zen hantxe, 1731. urtean. *Videcuruceta* (1865, DJE, 1/ 177. or.) izeneko etxe horretan bertan ere, Bernardo de Gabiola Lazpita musikaria jaio zen, 1880. urtean.

Dokumentazioan Berrizen arrunta den *Bidekurutzeta* izenaz agertzen bada ere, Abaitua aldeko *Bidekurutzeta* da honako hau, eta ez Sarria aldean aurkitzen dugun *Bidekurutzeta* (**Ikus Bidekurutzeta**). XX. mendeko aipuetan *Bide Kurutzeta* (1910, BUA, RU) eta *Bidecurutzeta* (1967, BUA, CE) idatzizko formak agertzen diren bitartean, azken hamarkadetan, lehen esan bezala, *Kartérukúa* era nagusitu da ahozkotasunean.

toponimia

*Bizkaian ohikoa da etxe izenak oso luzeak izatea, luzeenak Euskal Herrian, lehenengo osagaia auzoaren izena izaten delako. Sarritan auzo izena hasieran etxe baten izena zen. Etxe bakarra egon zen eta bigarren bat eraikitzean zerbait bereizgarri gehitu zioten berriari eta gehienetan zaharrari. Denboraren poderioz auzoa sortu zen eta etxe guztiek zuten hasiera bera dute izenean. Hori bai, ahoz gehienetan bigarren zatia besterik ez da erabiltzen. Kasu honetan bidegurutzean dagoen etxea da. Bizkaian* kurutze *eta horren laburpena den* kurtze *erabiltzen dira gainontzeko euskalkietan, berriz,* gurutze *da nagusi.*






*Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Bidearen kontran zegoen ostatua zen, eta, horregatik, aldaketaren bat jasan du, errepidearen gorabeherengatik edo handitu eta leiho batzuk balkoi bilakatu dituztelako. Bi isurkiko teilatua dauka, alde batean zabalagoa dena. Etxearen eskumaldea simetria ardatzaren arabera antolatuta dago, baina ezkerraldean atxikita beste gorputz bat dauka, atearekin eta leiho biribilarekin gainean. Interesgarriena eskumako etxea da, besteak beste, informazioa ematen duen inskripzioa baitu.

XIX. mendean errotutako estiloan eraiki zen baserria, erdialdea indartuta eta dinteldun baoekin. Leihoburuei moldura bat jarri zieten lehenengo solairuan. Gaur egun, hormetako harria bistan badauka ere, lehen estalita eta pintatuta zegoen, beheko eta lehenengo solairuetako balkoien eta leihoen harlandu ederrekin kontrastea eginaz. Ganbaran, ostera, dena luzituta zegoen. Leihoburuko inskripzioak honela dio: *"CASA POSADA DE VIDE CURUTCETA. EDI / FICADA POR DN JOAQN DE ZENGOTITA VENGOA / Y DA ANA TERESA DE BERANO AGUIRRE CON / SORTES Y SU HIJO DN FRANCO AÑO DE 1832".*

# Abaituburu

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa:



*43° 10'59"* *2° 34'28"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Eraikin berria da honako hau, *Abaitua* (**Ikus Abaitua**) baserriaren goiko aldean egindakoa. Ikerketa toponimikoaren harira, eraikin berria eta izen gabekoa izanik, jabeei proposatu zitzaien toponimia-irizpideak kontuan izanda izen bat jartzea. Dokumentazioan "*Abaituburu*" soroa agertzen zen, eta hain zuzen ere, hortik hartu dugu izena.

Txaleta 2008an egin zen, L formako oinplanoaren gainean. Pisu bakarra du, eta, alderik luzeenean, teilatupea ere gehitu zitzaion. Modernoa den arren, tradizioaren eragina oso nabarmena da, batez ere egurra erabiltzeko eran, kolore-joko ederra egiten duelako horma luzitu zuriekin. Bizitasun handia ematen diote teilatuaren egiturak, baoen pertsianek eta angeluan dagoen aterpeko zutikoek.

toponimia

*Bizkaian ohikoa da etxe izenak oso luzeak izatea, luzeenak Euskal Herrian, lehenengo osagaia auzoaren izena izaten delako. Sarritan auzo izena hasieran etxe baten izena zen. Etxe bakarra egon zen eta bigarren bat eraikitzean zerbait bereizgarri gehitu zioten berriari eta gehienetan zaharrari. Denboraren poderioz auzoa sortu zen eta etxe guztiek zuten hasiera bera dute izenean. Hori bai, ahoz gehienetan bigarren zatia besterik ez da erabiltzen. Kasu honetan Abaitua auzoaren goiko etxea da, izenak argi erakusten duen bezala.*



**_Nuévo Nomenclátor_**

**_Provincia de Vizcaya_**

**_Partido judicial de Durango_**

**_Ayuntamiento de Verriz_**

| Nombres de las poblaciones y viviendas | Clase de las mismas | Distancia a la cabeza del Ayuntamiento |
|---|---|---|
| *Abáitua* | *Casa de labor* | *700 metros* |
| *Abáitua - Árnaga* | *Casa de labor* | *700 metros* |
| *Abáitua - echevarría* | *Casa Posada* | *680 metros* |
| *Abáitua - echevarría de abajo* | *Casa* | *685 metros* |
| *Abáituco - errotéa* | *Molino* | *770 metros* |
| *Abáituco - oléa* | *Molino* | *760 metros* |
| *Abáitu - Videcrucéta* | *Casa Posada* | *700 metros* |
| *Aguírre-Sacóna* | *Casa de labor* | *2,600 metros* |
| *Arcocha* | *Casa de labor* | *1,390 metros* |
| *Arechandieta* | *Casa de labor* | *600 metros* |
| *Arieta* | *Casa de labor* | *1,500 metros* |
| *Arriortúa* | *Casa de labor* | *640 metros* |
| *Batarrítas* | *Casa de labor* | *400 metros* |
| *Besóitas* | *Caserio* | *2,600 metros* |
| *Besóita-beitia* | *Casa de labor* | *2,300 metros* |
| *Besúen* | *Casa de labor* | *5,500 metros* |
| *Cochera* | *Casa de labor* | *400 metros* |
| *Descárga* | *Casa de labor* | *1,800 metros* |
| *Echáburu* | *Casa de labor* | *600 metros* |
| *Yturriózaga* | *Casa de labor* | *600 metros* |
| *Láriz* | *Casa de labor* | *2,700 metros* |
| *Larizgoítia* | *Casa de labor* | *2,800 metros* |
| *Lasúen* | *Casa de labor* | *2,900 metros* |
| *Legorréta* | *Casa de labor* | *380 metros* |
| *Lupíta* | *Casa de labor* | *3 kilometros* |
| *Merced (La)* | *Convento de Monjas* | *700 metros* |
| *San Lorénzo* | *Hermita y casa* | *2 kilometros* |
| *Ugaldeás* | *Casa de labor y molino* | *2 kilometros* |
| *Videbarrieta* | *Casa* | *590 metros* |
| *San Cristóbal* | *Hermita* | *5 kilometros* |
| *Vérriz* | *Caserio y Parroquia* | ------------- |

*BUA / Udal izendegia, 1859.*

# Abaituetxebarria (-a) etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Abáittutxébarridxe / Inés Pótolena



43° 10'56" 2° 34'27" Berriz Iruditan / J.A. Ramos

*Abaitua* inguruko beste baserri-etxeetako bat dugu honako hau. Izenak, hots, *Abaitua nuevo* (1825, PE/1825), erakusten duen moduan, garai batean etxeen artean berriena zen, eta seguruenik XIX. mende hasieran eraiki zuten. Lehen aipu horretatik aurrera, dokumentazioan beti agertzen zaigu *Abaituako etxebarria* moduan: *Abáitua-echevarria* (1859, BUA, Nmcr), *Abaitua-Echevarria* (1878, DJE, 4/ 86. or.) eta *Abaituaechevarria* (1967, BUA, CE), XX. mendean. Auzotarren artean, *Abáittutxébarridxe* moduan ezagutzen da, hori baita ahozko era. *Inés Pótolena* forma ere erabiltzen da nonbait.

XIX. mendeko baserri etxea, goranzko tendentzia jarraituz jasoa. Izan ere, hiru solairu eta ganbara ditu eta fatxada nagusiko baoak hiru ardatzetan antolatuta dauzka eta nabarmenena erdikoa da. Horregatik, atearen gainean balkoia dauka, harrizko mentsula moduko bat dena, burdinazko karelarekin. Eta goragoko solairuetan, leihoak, aldekoak bezalakoak. Ganbarakoak txikiagoak dira. Eraikitzeko harlangaitza erabili zuten, jatorriz estalita eta margotuta egongo zena, eta kantaletan eta bao guztietan, dinteldunak, harlandu bikaina. Ateburuan etxearen izenarekin inskripzioa dago. Teilatua bi isuritakoa da.

*"... la casería rústica titulada Abaitua Echevarria,... situada en la barriada de San Lorenzo jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende con inclusión de los terrenos de los cuatro costados que cortan a plomo las sacas del tejado, treinta y ocho estados cuadrados superficiales de planta solar, y la que se compone de sus correspondientes cuadras y habitaciones..."*
*DJE 1/181 or. (1865)*

*"...consta de tres viviendas, una de ellas es de piso llano, dos pisos altos o principales y desban, las otras dos de piso llano, alto y desban, ocupa una planta solar de trescientos veinte y un metros con inclusión de su plazuelita de enfrente y dell costado sudeste..."*
*DJE 4/86 or. (1878)*

toponimia

*Bizkaian ohikoa da etxe izenak oso luzeak izatea, luzeenak Euskal Herrian, lehenengo osagaia auzoaren izena izaten delako. Sarritan auzo izena hasieran etxe baten izena zen. Etxe bakarra egon zen eta bigarren bat eraikitzean zerbait bereizgarri gehitu zioten berriari eta gehienetan zaharrari. Denboraren poderioz auzoa sortu zen eta etxe guztiek zuten hasiera bera dute izenean. Hori bai, ahoz gehienetan bigarren zatia besterik ez da erabiltzen. Kasu honetan Abaitua auzoko etxe berria da, izenak argi erakusten duen bezala.*



# Abaituerrota

etxebizitza

Aldaerak: Eskonduena
Ahozkoa: Éskonduna

*"... el molino llamado Abaitua errotea radicante en dicho barrio de San Lorenzo... es de una vivienda, consta en su piso llano [de cocina], de un dormitorio y la sala del Molino y dos moliendas y cuadra además. El piso principal de tres dormitorios y pajar, y encima de estos desban, ocupa una planta solar de doscientos setenta metros incluso lo que ocupan sus tejabanas. Los antusanos de este molino miden ciento setenta y nueve metros cuadrados..."*
*DJE 4/86 or. (1878)*



*43° 11' 2"* *2° 34' 18"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

XIX. mendetik dokumentatuta dugu *Abaitua* inguruko errota hau *Abaituerrota* (1859, BUA, izendegia) izendapenaz, nahiz eta 1857. urtean egindako eraikin-erroldan *Escondua* (1857, BUA, Viv) izenez ere ageri. Hala ere, XIX. mendetik hona sorturiko dokumentazioan *Abaituerrota* izan da formarik ohikoena. Aitzitik, auzotarren artean eta batez ere XX. mendearen bigarren erdialdetik gaur egunera arte, *Éskonduna* izan da ahozko formarik erabiliena.

Izenak dioen moduan, errota izandako baserria da, oraindik produkzio gunearen hainbat elementu kontserbatzen dituena. Hiru bolumenez osatuta dago eta U forma hartzen du guztiak. Oro har, harlangaitza erabili zuten hirurak jasotzeko eta harlandua, kantaletan. Errotari dagokion etxea erdialdekoa da eta honen bi bao harlanduz egin zituzten, atea eta gaineko leiho luzea, biak dinteldunak. Eskuma aldeko eraikinean ere beste leiho bi daude silarriez eginak, lehenengo solairukoa eta ganbarakoa, txikiagoa dena. Beste guztiak, XX. mendean berriztatu zutenean, zabaldu zituzten.

toponimia

*Bizkaian ohikoa da etxe izenak oso luzeak izatea, luzeenak Euskal Herrian, lehenengo osagaia auzoaren izena izaten delako. Sarritan auzo izena hasieran etxe baten izena zen. Etxe bakarra egon zen eta bigarren bat eraikitzean zerbait bereizgarri gehitu zioten berriari eta gehienetan zaharrari. Denboraren poderioz auzoa sortu zen eta etxe guztiek zuten hasiera bera dute izenean. Hori bai, ahoz gehienetan bigarren zatia besterik ez da erabiltzen. Kasu honetan Abaitua auzoko errota dugu. Errota hitza gehiago jakiteko irakurri* **Bekoerrota** *izeneko sarrera Okango kofradian.*




# Abaituiturriondo

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa:



43° 10' 54"    2° 34' 33"    *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*Abaitua* (**Ikus Abaitua**) baserriaren inguruan egindako txaleta. Gertu duen *Abaituko iturriaren* eraginez hartu du izena, bertako toponimoa mantendu nahian.

XX. mendeko bigarren erdialdeko txaleta dugu hau. Bi isurkiko teilatua du, eta egitura ez da simetrikoa, eskuinaldea asko handitu delako garajea hor kokatzeko. Hala ere, teilatuaren gailurra da fatxadaren ardatza antolatzen duena, horren azpian dagoelako teilatupeko balkoi bakarra eta sarrerako arkudun atartea, eta alde banatan kokatu dira leihoak: bakarra, ezkerraldean, eta beste bi, eskuinaldean. Horma zuriei bizitasuna ematen diete baoen egurrezko pertsiana ilunek.

toponimia

*Bizkaian ohikoa da etxe izenak oso luzeak izatea, luzeenak Euskal Herrian, lehenengo osagaia auzoaren izena izaten delako. Sarritan auzo izena hasieran etxe baten izena zen. Etxe bakarra egon zen eta bigarren bat eraikitzean zerbait bereizgarri gehitu zioten berriari eta gehienetan zaharrari. Denboraren poderioz auzoa sortu zen eta etxe guztiek zuten hasiera bera dute izenean. Hori bai, ahoz gehienetan bigarren zatia besterik ez da erabiltzen. Kasu honetan Abaitua auzoan iturriaren ondoan dagoen etxea da.*



# Abaitvola

etxebizitza

Aldaerak: Abaituko olea
Ahozkoa: Olá

*"... el Molino llamado Abaituco-olea radicante así bien en dicho barrio de San Lorenzo... es de dos viviendas, una de ellas consta en el piso llano de cocina, un dormitorio, horno y cuadra, en el piso principal de dos dormitorios y pajar, y encima de estos desban. La otra vivienda en su piso llano de cocina, dos dormitorios, sala de una molienda y cuadra y encima desban, ocupa una planta solar de trescientos cincuenta y ocho metros incluso lo que ocupa su tejabana. El antusano de este molino mide doscientos sesenta y seis metros..."*
*DJE 4/86 or. (1878)*



*43°10'58"* *2°34'18"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*Oka errekaren* urak aprobetxatzen zituen ola da, *Mertzedarien Komentuaren* (**Ikus Mertzedariak**) ondoan kokaturik. XIX. mendetik dokumentatuta dugu, eta aipu guztietan modu berean agertzen zaigu: *Abáituco-Oléa* (1859, BUA, Nmcr), *Abaituco-olea* (1878, DJE, 4/ 86. or.) edota *Abaituco Olea* (1910, BUA, RU). Berriztarren artean, *Olá* da ahozko formarik erabiliena.

*"… Pedro de Isunza y Francisco de Isunza, y consortes, sus hijos y curador, con Pedro de Abaitua, vecinos de la anteiglesia de Berriz. Apelación de sentencia sobre denuncia de obra nueva de ferrería en el lugar de Abaitua, que perjudica a la ya existente de Abaroa, propiedad de los actores…"*
*1731/1732*

Izenak burdinaren produkzioarekin lotura badu ere, errota moduan da ezaguna. XIX. mendean zena baino txikiagoa ikusten dugu gaur egun, nahiz eta errota-harri bi dituen. Bista-bistan dauka oraindik izaera industriala, azpiko arkuak, gangak eta aldamenetako kontrahormek adierazi legez. Harlandu ederraz burutu zituzten aurreko guztiak, erdiko leihoa eta atea bezala. Hormak luzituta daude. Oro har, XVIII. mendeko eraikina dirudi, seguruenik burdinola zenekoa.

toponimia

*Bizkaian ohikoa da etxe izenak oso luzeak izatea, luzeenak Euskal Herrian, lehenengo osagaia auzoaren izena izaten delako. Sarritan auzo izena hasieran etxe baten izena zen. Etxe bakarra egon zen eta bigarren bat eraikitzean zerbait bereizgarri gehitu zioten berriari eta gehienetan zaharrari. Denboraren poderioz auzoa sortu zen eta etxe guztiek zuten hasiera bera dute izenean. Hori bai, ahoz gehienetan bigarren zatia besterik ez da erabiltzen. Kasu honetan Abaitua auzoko ola, hau da burdina lantzeko edo burdin lingoteak sortzeko lantegia. Sarritan errota lanak ere egiten ziren oletan antepara aprobetxatuz. Hala ere gogoan izan ola hitzak beste adiera desberdinak ere izan dituela.*

# Abeletxe

etxebizitza

Aldaerak: Abeletxebarria
Ahozkoa: Abéletxena



Berriz Iruditan / J.A. Ramos

*"... la casa rústica titulada Abelechea... situada en la Cofradía o barriada de San Lorenzo jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende con su tejabana cincuenta y cinco estados, equivalentes a doscientos nueve metros cuadrados superficiales de planta solar... y la que se compone de pisos bajo y alto y desbán, con sus correspondientes divisiones y habitaciones..."*
*DJE, 1/229. or. (1866)*

Jatorrizko baserria bota zenean, XX. mende amaieran, horren atzealdean egin zen egungo baserria. Lehengo baserriaren izena mantendu du, nahiz eta batzuetan *Abeletxebarria* moduan izendatzen dute herritarrek. Dokumentazioan, lehengo baserriari dagokionez, topatu dugun lehen arrastoa 1745ekoa da, Bizkaiko su-erroldetan. Gerora, dokumentazio guztian izena mantendu da. Auzotarren artean, *Abéletxena* da formarik erabiliena. XX. mendearen azken hamarkadan baserriaren ingurua zeharo aldatu da, eta bertan eraikitako etxebizitza multzoak *Abeletxe auzunea* izena hartu du.

Txaletari eta auzuneari izena eman dion baserri zaharra, bota zutena, XIX. mendeko eraikina izan zitekeen. Argazki zahar eta pintura batzuen arabera, antolamendu sinpleko fatxada zeukan: aldamenean zituen atea, eskailerak igota, eta lehenengo solairuko balkoi luzea. Itxuraz, etxea txikia zen eta momenturen batean handitu egin zuten, ganbara aldean sumatzen zirelako horren arrastoak. Harlangatza erabili zuten eraikitzeko eta harlandua, atean baino ez, beste bao guztiak egurraz zabaldu zituztelako. Gainera, ganbarako pisuan egurrezko egitura zuen, tartekako txori-tokiekin. Teilatua bi isuritakoa zeukan eta hegalari eusteko, egurrezko besoez baliatu ziren.

toponimia

*Abeletxea, izenak berak dioen bezala, abereak gordetzeko etxea da, askotan baserritik urrun. Ola edo kortabasoekin gertatu zen bezala hasieran abereak gordetzeko eraiki zena bizitzeko etxe bihurtu zen. Hitz honen etimoa erabat gardena da abere+etxe. Baina deigarriena dugu abere hitzaren etimoa. Abereak etxeko animaliak dira, bereziki behiak eta behorrak eta hitza latineko habre-tik dator gaztelaniazko "haberes" (jabetzak) bezala.*

# Agirresakona (-a)

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Agérresakon



43° 10' 48" 2° 32' 59" *Berriz Irudiitan / J.A. Ramos*

*"... la casa llamada Aguirresacona... radicante en jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz [Cofradía de San Lorenzo], y comprende su planta solar cuatrocientos cincuenta y ocho metros, la que consta de dos viviendas componiéndose de planta baja principal y desban; la planta baja consta de dos cocinas, cuadras, cuartos y tejabana; el piso principal de cuartos..."*
*DJE, 5/ 14. or. (1881)*

Berriz eta Zaldibar arteko mugan eraikitako baserria da. XVII. mendean topatzen dugu lehen arrasto dokumentala, hots, *Aguirre sacona* (1662, BAHP, A225/32. or.), eta hortik aurrera, dokumentazioan ia aldaketarik gabe mantendu da: *Aguirre Sacona* (1796, Bizkaiko su-erroldak), *Aguírre-Sacóna* (1859, BUA, Nmcr) eta *Aguirre-sacona* (1967, BUA, CE). Berriztarren artean, *Agirre* (**Ikus Agirre**) baserriarekin gertatzen zen moduan, *Agérre* ahozko eratik abiatuta *Agérresakon* dokumentatu dugu.

Eraberritze handia izan du baserriak, eta jatorrizko elementu batzuk baino ez ditu kontserbatzen gaur egun. Eraikinaren neurri eskergak eta taxuketak aldi desberdinetan egindako handitzeen berri ematen digute, eta bereziki harrien tailu diferenteek eta fatxaden tratamenduak hala aditzera ematen dute. Elkarren ondoan dauden bi etxe badirudite ere, argazki zaharrei esker, badakigu etxe nagusia ezkerraldekoa zela, XVII. mendean hedatutako estiloan jasotakoa.

Beranduago, eskumaldea handitu egin zuten, atxikitako etxe baten itxura emanaz, teilatu eta guzti. Harrigarriena da etxe berriak teilatuaren isurki bat ohiko eran egina duela, eta bestea urez betetako estalki laua dela, fabriketan XX. mende hasieran egiten hasi ziren horietakoa.

toponimia

Agirre *oso arrunta da toponimian eta "agerian" dagoen leku bat adierazi nahi du. Gure Euskal Herria menditsua denez ia herri guztietan dugu Agirre izeneko etxe bat. Mendebaldeen dagoen Agirre Bizkaiko Artzentales herrian dago eta ekialdeen Santa Grazin, Zuberoan. Ahoz ohikoa da* Agerre *esatea baina Bizkaian ahoskera hori nahiko berria da. Iparraldean, berriz, zaharra da eta* Agerre *deitura* D'Aguer *moduan frantsestu zen. Deitura honetatik sortu zen* Daguerrotipo*, egungo argazkien aintzindaria. Beraz, kasu honetan kontrako esangura duten izen bi ditugu* sakon *berba* agirreren *kontrakoa baita.*





*Agirresakona, 1953, Guregipuzkoa.net/Caserío Aguirresacona © CC BY-SS: Ojanguren, Indalecio.*

Ostean horma zaharra dauka, XVI. edo XVII. mendekoa izan daitekeena, eta aurrean bistan utzi dituzte beranduagokoak, aipagarrienak izanik jatorrizko etxearen behealdeko aldamenetako gorputzak. Bertako kantalak zein leiho txikiak harlanduzkoak dira, gaur egun itsututa badaude ere. Etxe zaharrak egurrezko dintelarekin hornitutako atarte zabala zeukan, eta hari eusteko egurrezko zutikoa zuen erdian.

Gaineko solairuak zurezko egitura zuen, leiho bi, eta tarteko hormak pintatuta. Ganbaran, berriz, frontalaren formari egokitutako beste leiho bi ditu. Etxe zaharrenaren eta berriagoaren arteko banaketa bistan dago oraindik ere fatxada nagusian, silarrien norabideari erreparatzen badiogu. Gaur egun, leiho, balkoi eta ate berriak zabaldu dituzte, eta egurrezkoa zena hormigoiaz ordezkatu dute, nahiz eta saiatu diren itxura zaharra mantentzen.

Armarriak agerian uzten du etxeak eta etxekoek garrantzia zutela. Armarri soila zen, harrizko plaka batean zizelkatuta. Bere garaian zutikoaren gainean zegoen, eta burdinazko grapa batzuen bidez lotzen zitzaion egurrari. Egun, fatxadan dago, horman sartuta.

# Apaizetxea

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Apézetxea



43°10'29" 2°34'36" *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Lau etxebizitza dituen eraikina da, denak teilatu bakar batekin estalita. Horietako bakoitza hiru pisuren eta beste horrenbeste ardatzen arabera antolatzen da, oso modu simetrikoan: erdian sarrerako atea, gainean leiho luzea, horien aldeetan leiho motz bana eta ganbaran beste hiru leihotxo.

Hala ere, fatxada, osotasunean hartuta, orekatua da, eta horizontaltasuna tarteka hausten dute etxeon ate eta leiho luzeek. Bizitasuna emateko, horma luzituen eta bao guztien harlandu koloretsuen jokoa aipatzekoa da. XIX. mende amaieran eta XX. mendean zabaldu zen estiloan egina da.

toponimia

*Herri gehienetan, guztietan ez bada, dugu apaizaren bizitokia den etxe bat. Batzuetan elizaren zati bat da eta ez du izenik, baina sarriago berezko etxea da, ez baserria, elizaren ondoan edo gertu eraikia. Izen bat baino gehiago agertzen da Abadetxea eta Abadena zaharragoak izaten dira Abadetxea baino.*



# Aretxaga

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Aátxa / Átxa / Aátxaga

*"... la casería de Arechaga y sus pertenecidos radicante en jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz... se compone de un area de setenta y nueve estados equivalentes a trescientos un metros, tiene piso bajo, primera habitación y camarote... zaguan y plazueleta..."*
*DJE, 4/23. or. (1878)*



*43° 11' 25"* *2° 34' 39"* *Berriz Iuditan / J.A. Ramos*

Besoita aldetik Andikoara doan bideari jarraituta aurkitzen dugu XVII. mendeko *Arechaga* (1685, BAHP, A962/32. or.) baserria. XVIII. mendeko Bizkaiko su-erroldetan forma bera mantentzen du, *Arechaga* (1704), hain zuzen ere, eta orokorrean aldaketarik gabe mantendu da: *Arechaga* (1825, PE/1825) eta *Arechaga* (1910, BUA, RU). Auzotarren artean, *Aátxa*, *Átxa* edo *Aátxaga* dira formarik erabilienak.

Baserri-etxe ederra da, 1800 inguruko baserrien tankeran jasoa. Egun simetrikoa ez bada, aldamenean erantsia daukan gorputzagatik da, beranduago jaso zena atearen egurrezko dintelak ondo islatzen duen moduan. Etxe originala sarrerako atarteko arkuaren arabera ordenatuta zegoen. Beheko solairuan, haren aldeetan, leiho bana dauka.

Bestalde, lehenengo solairuan lau leiho ditu, behekoekin lerrokatuta, eta arkuaren gaineko biak. Ganbaran, beste bi leiho dauzka. Harri ona erabili zuten eraikuntzan, nahiz eta harlangaitzezkoak izan hormak. Barrenean, etxe zaharragoaren silarriak ikus daitezke oraindik. Kantalak, arkua eta leiho guztiak harlanduzkoak dira. Bi isurkiko teilatua dauka.

toponimia

*Bizkaian eta Araban oso arrunta da toponimoetan aretx agertzea, baina hitz honek lehen ez omen zuen egun duen esangura. Badirudi antzina aretx ez zela "haritza" Quercus robur, edozein "zuhaitz" baizik. Dena dela, nolako zuhaitza izan behar zen orain dela bostehun urte baino gehiago adierazgarria izateko.*





# Aretxandieta *etxebizitza*

Aldaerak:
Ahozkoa: Átxanieta



43° 10' 50" 2° 34' 37" Berriz Iruditan / J.A. Ramos

*"... la casa rústica titulada Arechandieta... situada en la Cofradía o barriada de San Lorenzo jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende sesenta estados equivalentes a doscientos veinte y ocho centiareas, y la que se compone de pisos bajo y alto y desban, con sus correspondientes cuadras, divisiones y habitaciones..."*
*DJE 1/238 or. (1866)*

Lehengo baserria eraitsi egin zuten, orain dela 40 urte gutxi gorabehera. Baserria botatzerakoan, bertan zeuden errenteroak baserri horren soroak erosi, eta egungo baserria egin zuten, zaharra zegoen tokitik gertu. *Aretxandieta* baserrian bizi izandakoak zirenez, izen horrekin ezagutu da eraikin berria ere.

Baserri zaharraren gaineko lehen arrasto dokumentala 1745ekoa da, hots, *Arechandieta* (Bizkaiko su-erroldak), eta izen hori mantendu da dokumentazioan 1967ra arte. Urte horretako Berrizko Udalak eginiko eraikin-erroldan agertzen da azkenengoz. Auzotarren artean, *Átxanieta* moduan izendatzea da arruntena.

Desagertutako baserri baten izena daraman etxeak, honako hau dagoen lekutik oso gertu zegoen. Oraintsu berriztatu egin dute, eta 40 bat urte dela jasotakoari sarrera albora aldatu diote. Etxearen fatxada oso modu orekatuan ordenatuta dauka. Nahiz eta isurki biko teilatuaren ardatza erdian ez egon, horren azpian kokatutako bi pisuetako balkoi txikiak dira gehien erakartzen dutenak. Bestelako baoak leihoak eta idi-begi bat dira. Ganbaran, izkina batean txori-tokia dauka, tradizioari jarraituz. Beheko solairuan harria erabili zuten, eta gainekoan hormak zurituta daude, tarteka harriren baten kolore gorrixkak alaituta.

## toponimia

*Bizkaian eta Araban oso arrunta da toponimoetan* aretx *agertzea, baina hitz honek lehen ez omen zuen egun duen esangura. Badirudi antzina* aretx ez *zela "haritza"* Quercus robur, *edozein "zuhaitz" baizik. Amaieran ageri den eta atzizkiak bi esangura ditu "lekua" eta plurala. Beraz, "Aretx handia" edo "Aretx handiak" bezala ulertu behar dugu. Zer nolako zuhaitza izan behar zen orain dela bostehun urte handia zela esateko!*



# Arkotxa

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Arkótxe



43° 11' 4" 2° 34' 23" Berriz Iruditan / J.A. Ramos

*Done Laurendi* (**Ikus Done Laurendi**) ermitatik gertu kokatzen den baserri honen gaineko lehen aipuak XVIII. mendean aurkitzen ditugu, *Arcocha de Yuso* forma erregistratzen da 1704. urteko lehen su-erroldan. Hortik aurrera, izenaren bigarren osagaia galtzen da, eta *Arcocha* era nagusituko da: *Arcocha* (1796, Bizkaiko su-erroldan), *Arcocha* (1826, BAHP, A355/15. or.) edo XX. mendeko dokumentuetan *Arcocha* (1967, BUA, CE). Berriztarren artean, *Arkótxe* da ahozko formarik erabiliena.

Gaur egun duen itxura ez da jatorrizko etxea jaso zutenean zeukana, XVIII. mende inguruan. Izan ere, azkeneko berriztatze lanetan harlangaitza estaltzen zuen kapa kendu diotenetik, garbi-garbi ageri dira etxe haren kantaletako harlanduak eta fatxadako baoen antolamendua. Askotan ikusi duguna zeukan, hau da, pisu bi eta ganbara, hiru ardatzetan antolatuta eta erdikoa, indartuta. Honetan atea zuen erdian, gainean leiho luzea eta ganbarako txikitxoa. Denak dinteldunak eta harlanduz inguratuta. Beranduago, etxea ezkerraldetik handitu zutenean, bi isuritako teilatuaren gailurra ere lekuz aldatu zuten, berriaren erdian kokatzeko.

toponimia

*Nahiz eta izen hau leku baten baino gehiagotan ageri den (Durangon, adibidez, izen bereko kalea dugu), ez dugu etimoari buruzko inolako teoriarik.*

# Arrieta

etxebizitza

Aldaerak: Arieta
Ahozkoa: Árieta



43° 11' 12" 2° 34' 5" Berriz Iruditan / J.A. Ramos

*"... la casería rústica titulada Arrieta...situada en el barrio de San Lorenzo jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende con inclusión de su antusano horno y tejabana zaguan y un poquito de huerta doscientos noventa y seis estados equivalentes a mil cuatrocientos y dos metros de cabida, y la que se compone de piso bajo y alto, con sus correspondientes cuadras y divisiones y habitaciones..." DJE 2/167or. (1868)*

*Arrieta* baserri aurrean dugun eraikin akzesorioan "*1840*" agertzen bada ere, data hori eraikin horrekin lotuta dago, baserriaren gainean topatutako arrasto dokumentalak XVIII. mende hasierakoak baitira, *Arrieta* (1704, Bizkaiko su-erroldan). Hortik aurrera dokumentazioan aldaera batzuk agertzen dira, batzuetan tarteko –r bat galtzen duelarik: *Arietta* (1758, BAHP, A460/32), *Arieta* (1859, BUA, Nmcr), *Arrieta* (1865, DJE, 1/ 168. orr). XIX. mende amaieratik eta XX. mendean zehar, kontsultatu ditugun zentsoetan *Arieta* era dokumentatzen da gehienetan. Forma hau da, *Árieta*, ahozkotasunean erabiltzen dena.

XIX. mendean ohikoa bihurtu zen estiloan jasotako baserria da. Hau da, zabaleran barik, goranzko tendentzia aintzat hartzen duena. Pisu bi eta ganbara ederreko etxea da, goian alderik aldeko balkoia duena, egurrezko beso handiek eutsia. Sarrerako ate zabala teilatuko gailurraren arabera jarrita dago eta, gaineko balkoi luzea eta aldamenetako leiho denak lez, harlandu ederrez eratutakoa da. Isuri biko teilatua badu ere, ez da simetrikoa, ezkerraldean zabalagoa delako. Honetan ere, atea eta bestearekin lerrokatutako leihoak harlanduzkoak dira. Azkeneko berriztatzean hormetako harlangaitza bistara atera diote, baina bere egunean luzitu eta pintatuta egongo zen.

toponimia

*Leku izen arrunta eta argia "harri asko dagoen lekua" adierazten duena. Arrieta oso toponimo arrunta da Euskal Herri osoan eta Hegoaldean, esaterako izen hau duten etxeak daude, edo egon dira, ondoko herrietan- Araban Iruraitz-Gaunan; Bizkaian herri izena izateaz gain, hau eta Elorrioko Miota auzoan; Gipuzkoan Altzan, Amezketan, Beasainen, Villabonan, Donostian, Gaintzan, Hernanin, Oiartzunen, Soraluzen, Zegaman eta Zizurkilen; Nafarroan Zigan dugu. Iparrraldean* Harrieta *da alderea.*



# Arriortua (-a)

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Arrátu

*"... la casería de Arriortua y sus pertenecidos... radicante en jurisdicción de la anteiglesia de Berriz... situada en la barriada de San Lorenzo... consta de piso alto y bajo,... contienen con inclusión del solar de la casa y mugas cuatro mil cuatrocientos y un estados equivalentes a una hectárea y siete áreas y cuarenta y dos centiareas... "*
*DJE 3/238 or. (1877)*



*43° 10' 54"* *2° 34' 35"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Jatorrizko baserriaren gaineko lehendabiziko aipuak 1704ko Bizkaiko su-erroldetan aurkitzen ditugu, *Arriortua*. Harrezkero, izena mantendu da aldaketa gutxiekin: batzuetan, *Arreortua* (1833,BAHP, A508/35. or.) aurkitzen dugu, eta beste batzuetan *Arratua* (1905, BUA, 40. or.) ere aurkitu izan dugu. Ahozko transmisioan, *Arrátu* era erabili izan da. Eraikin honen atzealdean beste etxebizitza bat dago *Arriortuabarri* izenarekin ezagutzen dena (**Ikus Arriortuabarri**).

XIX. mendeko baserria zegoen lekuan jasotako etxe berria da gaur egungoa. Zaharra etxe handia zen, trinkoa eta leiho gutxikoa, horma luzituekin, eta harlandua soil-soilik fatxadako ateetan eta etxearen kantaletan erabili zuten. Berriak lehengoaren neurriak mantendu ditu oinplanoan, baina gorantz garaiera irabazi du, bigarren solairua jaso egin dutelako.

Fatxada eta etxearen taxuketa zeharo desberdina da orain. Oso modu simetrikoan ordenatu dute, zaharra ez bezala. Bi gorputz bereizten dira alboetan, eta erdikoa, berriz, besteak baino sartuago dago, behetik goraino. Horretan dago sarrerako atea, eta gaineko balkoia, berriz, egurrezkoa da.

Gorago, teilatuari eusteko egurrezko egitura dugu, kanpoaldean zein barrualdean. Alboko bi gorputzetan leiho bana dago solairu eta alde bakoitzeko, denak egurrezko dinteldunak. Horma guztiak harrizkoak dira, erdialdeko goialdean izan ezik, adreilua baitauka. Harlandua, ostera, kantaletan eta baoen janbetan.

toponimia

*Leku izen honen osagaiak argiak dira harri, ortu eta plurala edo lekua adierazten duen -eta atzizkia. Ortu hitza, gaztelaniazko huerta bezala, latineko ortum-etik dator. Esanahia "harrietako ortua" dela suposatu behar dugu.*





# Arriortuabarria (-a) etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa:



*43° 10' 54"* *2° 34' 36"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Bizitza bakarreko txalet hau, *Arriortua* (**Ikus Arriortua**) baserriko atzeko landan egin zen, eta hortik datorkio izena, *Arriortuabarria* ("*Arriortuako etxe berria*").

XX. mendeko 80ko hamarkadan egindako etxe berria dugu. Arlo batzuetan tradizioa mantendu badu ere, oro har etxe modernoa da. Bi solairu eta ganbara ditu. Sarrerako atea beheko solairuko fatxada nagusiko izkina batean dago, arku txiki bat osatuz, lehenengoko solairuaren aldameneko paretan.

Fatxada hiru ardatzen arabera antolatu zuten, nahiz eta nagusiena lehen solairuko erdiko balkoi zabala izan, besteetan leihoak eta atea baitaude. Materialei dagokionez, harriz forratutakoa da beheko solairuko aurrealdea, eta adreiluzkoa beste guztia, ganbara aldeko frontala izan ezik, egurrezko egitura imitatuz egin zutelako. Teilatua bi isurkikoa da.

toponimia

*Leku izen honen osagaiak argiak dira harri, ortu eta barri, azken hau adierazten digu Arriortua baserri inguruan egindako etxe berria dela. Ortu hitza, gaztelaniazko huerta bezala, latineko ortumetik dator.*

# Batarrita

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Batárritte


43° 10' 42" 2° 34' 43" Berriz Iruditan / J.A. Ramos

"... la casería de Batarrita y sus pertenecidos radicantes en jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz... en la Cofradía o barriada de San Lorenzo y se compone de dos viviendas distribuidas en el piso bajo de portalada, cocina, cuartos y cuadras; en el principal de sala y dormitorios y en la parte superior de cuadras y pajares. La casa accesoria de en frente... consta de una vivienda con una cocina y cuadra en el piso bajo, y en la parte superior de cuartos dormitorios y pajares. Ocupan ambos edificios, con inclusión de la tejabana, horno, zaguanes y un retazo de huerta, doscientos cincuenta y tres estados equivalentes a nueve areas y sesenta y dos centiareas..."
*DJE 3/191 or. (1877)*

Topatutako lehen arrasto dokumentala 1704koa da, eta bertan Sallobente-Mendibil kofradiaren baitan agertzen den baserri bati erreferentzia egiteko erabiltzen da izen hau. Gerora izen hori mantendu da, eta errolda guztietan izen bera aurkitzen dugu. 1859ko udal-izendegian *Batarrítas* (1859, BUA, Nmcr.) izena agertzen zaigu, eta aipu horrekin erreferentzia egin nahi zaie inguruan aurkitzen ditugun etxeei: *Batarrita* eta *Batarritaetxebarriari* (**Ikus Batarritaetxebarria**). Egun bizitza biko baserria da, nahiz eta garai batean hiru familia bizi ziren bertan: baserriko bizitzan bi, eta baserriaren aurrealdean dagoen eraikinean beste familia bat. Azken eraikin hori erorita dago, eta dokumentazioan *Batarrita Arnaga* (1905, BUA, 40. or.) moduan agertzen da. Aipatu dugun moduan, aurrealdean

toponimia

*Berrizen badira* -ita *amaiera duten leku izen asko eta* Etxeita *kasuan hasieran* etxe *egon daitekeela pentsa daitekeen arren beste batzuetan hasierako osagaia pertsona izen bat izan litekeela pentsa genezake. Hori balitz kasu honetan* pater *izan genezake, baina datu gehiago beharko genuke zerbait ganoraz ondorioztatzeko.*





*Batarrita / Berriz Iruditan*

lehengo eraikuntza baten aztarnak aurkitzen ditugu, eta horiekin batera izkin batean harraska aurkitzen dugu. Antza denez, *Batarrita* baserrian aurkitzen dugun harraska hori inguruko beste etxeek ere erabiltzen zuten.

Baserri-etxe ederra dugu, bizitza bikoa eta XVIII. mende amaieran egin ziren etxe askoren antzera jasoa. Azkeneko eraberritzean hormigoia erabili dute balkoietan eta fatxada nagusiko harlangaitza desestali. Hala ere, jatorrizko etxearen itxura gorde du bete-betean. Bi solairu eta ganbara ditu, bi isurkiko teilatuaren azpian. Erdiko ardatzaren arabera antolatu zuten dena, eta sarrerako atartea da aipagarriena, bi arku dituelako. Gainean, balkoia dauka, burdinazko karelarekin, eta horrekin lerrokatuta, ganbarako leihoa. Bi pisuetako aldamenetan, leiho bana dauka. Bao guztiak harlandu ederraz burututa daude, baita arkuak eta kantalak ere. Ganbara egurrezko egitura imitatuz gauzatu zuten, eta horma estalita dago.




# Batarritaetxebarria etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Batárritte



43° 10' 49" 2° 34' 38" *Berriz Irudital / J.A. Ramos*

Gaur egun bi bizitza bereizten dira: *Batarritaetxebarria* eta *Errementari* (**Ikus Errementari**). *Batarritaetxebarria* 1872. urtean eraiki zen, aurrealdean dagoen inskripzioak dioen moduan. Udaletxeko dokumentazioan 1905ean eta 1967an topa-tzen ditugu horren arrastoak. Antza, baserriaren alboan, jabeak lan egiteko erabiltzen zuen eremua zegoen.

Etxe neoklasiko ederra dugu, XIX. mende amaieran eraikitakoa. Hiru pisu dauzka, teilatuaren jokoari esker. Izan ere, gailurra fatxada nagusiarekiko paraleloa da, baina erdian txapitula handi bat gehitu zioten, eta, horrela, ganbara zitekeena pisu arrunt bihurtu. Fatxada nagusiko baoen antolamendua garbia da, denak harlandu bikainaz zabalduta.

Txapitularen azpiko gunea dugu punturik deigarriena. Elkarren gainean kokatuta ditu atea, balkoi txikia eta balkoi luzea, txapitularen azpiko hiru baoak hartzen dituena. Aldamen

## toponimia

*Bizkaian ohikoa da etxe izenak oso luzeak izatea, luzeenak Euskal Herrian lehenengo osagaia auzo izena izaten delako. Sarritan auzo izenaren oinarria etxe baten izena da. Etxe bakarra egon zen eta bigarren bat eraikitzean zerbait bereizgarri gehitu zioten berriari, eta gehienetan zaharrari. Denboraren poderioz auzoa bohirtu zen eta etxe guztiek zuten hasiera bera dute izenean. Ahoz, gehienetan bigarren zatia besterik ez da erabiltzen. Kasu honetan* Batarrita *auzoko etxe berria da. Deigarria da holakoetan batzuetan* barri *gehitzea eta beste batzuetan, berriz,* etxebarri.





*Abaitua aldea XX. mende hasieran / Berriz Iruditan*

bakoitzean, bina leiho ditu pisuko, goragoko izkinetakoak txikienak izanik, ganbararen formari doituz. Beheko eta lehenengo pisuak bereizten dituen plaka klasiko bat dauka.

Hormak luzituta eta pintatuta dauzka, garaiko ohituraren arabera, eta etxeari buruzko informazioa ematen duen inskripzioa ikus daiteke lehenengo solairuko balkoi-buruan: *"CASA BATERRITA–ECHEVARRIA / ERIJIDA POR PEDRO DE ARIZNA- / BARRETA Y M. ANDRESA DE BER / RIZBEITIA CONSORTES AÑO 1872".*





# Bentatxu

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Bentátxu



*43° 10' 58"* *2° 32' 55"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*Santrokaz* inguruan koka-tzen den baserri honen gaineko lehen aipuak XIX. mendekoak badira ere, guk XX. mendeko dokumentazioan aurkitu ditugu erreferentzia gehienak: *Ventachu de Santrocas* (1905, BUA, 40. or.), *Ventachu* (1945, BUA, 37. or.) eta *Ventachu* 1967ko azken Udalerroldan. Auzotarren artean, *Bentátxu* moduan ezagutzen da Mallabia bidean kokatzen den Berrizko azken baserri hau.

Baserri-etxe soila da, XIX. mendean egindakoa. Bi isurkiko teilatuaren azpian fatxada sinpleko eraikina daukagu, bao gutxirekin antolatua. Beranduago etxea handitu zuten, eta simetrikotasuna galdu zuen. Aitzitik, jatorrian sarrerako atea erdian zeukan, harlandu ederraz inguratutakoa. Etxeko kantalak eta leihoak material berarekin zabaldu zituzten: atearen bi alboetan dauzkanak zein horiekin lerrokatuta lehenengo pisuan daudenak, baita ganbarako bakarra ere. Hormak harlangaitzaz jaso zituzten.

toponimia

*Izen gardena beste azalpenik behar ez duena. Aspaldian herri guztietan egoten ziren bentak eta berebiziko garrantzia zuten. Hasieran udalarenak ziren eta herriaren diru iturri bakarra ziren, alogeran zuenak udalari eman behar zion dirua dela eta. Bestetik bidaiarientzako gera-lekuak ziren, eta azkenik herrikoen, gizonezkoen hobeki esan, taberna.*





# Berriz

etxebizitza

Aldaerak: Palazioa / Markesarena
Ahozkoa: Palásixue / Markésiena



*43°10'29"* *2°34'39"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Gaur egun jauregi hau udalerriko gobernuaren etxea dugu, eta lehenbiziko aipuak topatzeko, denboran atzera egin behar dugu Erdi Aroraino. Dena den, eta landa-eraikinekin gertatu den bezala, honi buruzko aipuak Bizkaiko suerroldetan ere agertzen dira XVIII. mendean: *Berriz* (1704, 1796) eta *Verriz* (1745).

Hortaz, kasu honetan ere aldaera gutxi ezagutu dira, horien nabarmenena izanik *B* edo *V* erabiltzea izena idazterakoan. Gero, XIX. mende erdialdetik aurrera, *Palacio* (1857, BUA, Viv eta 1866, DJE, 1/ 247. or.) moduan agertzen da bakarrik, nahiz eta izendegian berriro ere *Vérriz* (1859, BUA, Nmcr) agertu.

XX. mendean, Berrizko markesa heldu zenean, berriztarren artean *Markesarena* izenez ezagutzen hasi zen eraikin hau, ahozko formarik erabilienak *Palásixue* edo *Markésiena* izanik. XXI. mende hasieratik Udaletxe bihurtu da, eta, ondorioz, izendapen hori ere darabilte herritarrek eraikinari erreferentzia egiteko.

Udaletxe bihurtutako jauregia da. Berriz izeneko dorretxearen lekuan, XIX. mendean jauregi

toponimia

*Herriari izen eman zion etxea dugu hau, denborarekin jauregia bihurtu zena. Bizkaian sarritan dugu gertaera hau eta horren ondorioz etxeak izena galdu eta* Torrea, Jauregia *edo, berriago den* Palazio *izena hartzen du. Gauzak honela etxea* Berriz *edo* Berrizjauregi *da. Esanahia iluna da. Toponimoetan ageri den -iz amaiera honek jabetza adierazten du eta gaur egun etxe izenetan erabiltzen dugun* -ena-*ren berdina edo antzekoa da. Beraz* Berriena *edo* Berrena *esangura du izen honek,* Berri- *hasiera zuen jaun baten izena alegia. Baina ez barri euskal hitza seguru asko* Berrius *izen latinoa baizik.*





*Berriz jauregia, Guregipuzkoa.net/Jardines y palacio de Aznar © CC BY-SS: Ojanguren, Indalecio.*

bat eraiki zuten. Sute batek hondatu egin zuen, eta horren gainean, orain ikusten dugun eraikina jaso zuten, Jose Maria Basterra arkitektoaren planoei jarraituz. Jauregi berria 1900ean eraiki zuten, eta hura egiteko arrazoia jabeei Berrizko markesgoa ematea izan omen zen.

Bi bolumenez osatutako eraikin hau sasoian indarrean zegoen estilo eklektikoan egin zen, lorategi eder batek inguratuta. Bolumenetako batek antzinako dorretxea gogorarazten digu, eta bestea jauregi-itxurakoa da. Nabarmena da dorretxearen bertikaltasunak ondoko jauregiaren horizontaltasunarekin mantentzen duen oreka, materialek eta koloreak ere horretara laguntzen dutelarik. Hala, lehenak Erdi Aroko dorretxeak dakarzkigu gogora, eta besteak, aldiz, jauregi barrokoak, batez ere baoen inguruko moldurengatik, arkitektura eklektikoak jarraitzen zituen postulatuen araberakoak.

# Besoitabeitia (-a) etxebizitza

Aldaerak: Besoitabeko
Ahozkoa: Besóitte béko / Besóittebéitti



*"... la casería rústica titulada Besoitaveitia... situada en la barriada de San Lorenzo jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende con su zaguan ochenta y tres estados cuadrados de planta olar, y la que se compone de piso bajo y alto a manera de entresuelo, y es de dos habitaciones..." DJE 1/194 or. (1864)*

*43° 11' 11"* *2° 34' 23"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Besoita aldeko baserria dugu honako hau, *Done Laurendi* (**Ikus Done Laurendi**) ermitaren parean kokaturik dagoena. Bizkaiko su-erroldan agertzen da lehenbizikoz, hots, *Besoyta Ueytia* (1704), eta izenaren bigarren osagaiak erakusten duenez, *Besoita* izeneko gunearen azpiko aldean kokaturik dago.

Dokumentazioan aldaera gutxi izan ditu, formetan v eta b tartekatzen direlarik: *Besoita Veitia* (1803, BAHP, A71/9. or.), *Besoitabeitia* (1857, BUA, Viv) eta *Besoita Veitia* (1905, BUA, 40. or.). 1859ko izendegian *Besóitas* agertzen da, eta inguruko baserri guztiak jasotzen dira erregistro horren baitan. Berriztarren artean, *Besóitte béko* edo *Besóittebéitti* dira erabilitako ahozko formak.

XX. mendearen erdialdean eraberritutako baserri-etxea da. Berrizko baserri askoren tradizioari jarraituz, arkudun atartea dauka sarrera gisa, eta horren aldeetan, leiho bana, dena harriz egina. Gaineko guztia luzituta eta pintatuta dago. Lehenengo pisuaren erdialdean, balkoia dauka, bi leihorekin alde bakoitzean, eta izkinetan, beste leiho bana, behekoekin lerrokatuta.

Ganbara aldean egurrezko egitura imitatu zuten, eta erdialdean, azpikoekin harmonia gordez, leihoak zabaldu zituzten, eta izkinetan, berriz, bina txori-toki. Bi isurkiko teilatua dauka. Inskripzioak honela dio: *"CASA BESOITABEITIA / PAULINO GOROSTIZA / JUANA ARROITAONANDIA / 10-8-1954"*.

## toponimia

*Berrizen badira -ita amaiera duten leku izen asko eta* Etxeita *kasuan hasieran* etxe *egon daitekeela pentsa daitekeen arren beste batzuetan hasierako osagaia pertsona izen bat izan litekeela pentsa genezake. Hori balitz kasu honetan* Beso *edo antzeko zerbait izan genezake, baina datu gehiago beharko genuke zerbait ganoraz ondorioztatzeko. Kasu honetan* beheko aldekoa *dela esaten digu.*



# Besoitagoena (-a)

etxebizitza

Aldaerak: Gonengoa
Ahozkoa: Gónengue / Besóitte gónengue



*43° 11' 19"* *2° 34' 31"* *Berriz Irudítan / J.A. Ramos*

Besoita etxe-multzoan aurkitzen den baserri honen gaineko lehen aipamena 1825eko polizia-erroldan aurkitzen dugu, *Besoitagoena* (1825, PE/1825), hain zuzen ere. Dokumentazioan oro har aldaketa gutxi izan ditu, *Besoitagoena* (1849) BAHP, A210/37. or.) eta *Besoita gonengua* (1905, BUA, 40. or.) izanik formarik erabilienak. Arestian aipatu izan dugun moduan, 1859an *Besóitas* (BUA, Nmcr) agertzen da erregistratuta beste baserriekin batera. Ahozkoari erreparatuta, *Gónengue* edo *Besóitte gónengue* formak erabiltzen dira gehien.

Oraintsu berriztatu duten baserri etxea da, aldi desberdinetako obrak antzematen zaizkiona, bai silarrietan, baita XVI. mendekoa izan daitekeen leiho baten hegi molduratuan, "AÑO DE 1779" dioen inskripzioa duelako edo, orokorrean, XVII. mendean zabaldu zen etxeen tankerakoa delako. Hau da, hiru gorputz eta erdikoan, atartea, zurezko dinteldunа, harkantoien gainean jarria. Alboetakoak irtenago daude, harlangaitzezko hormekin eta harlandua, kantaletan eta leiho ertzetan. Gainekoak egurrezko egitura du eta hormak adreiluzkoak ditu. Ganbaran, sarritan ikusten diren txori-tokiak.

toponimia

*Berrizen badira -ita amaiera duten leku izen asko eta* Etxeita *kasuan hasieran etxe egon daitekeela pentsa daitekeen arren beste batzuetan hasierako osagaia pertsona izen bat izan litekeela pentsa genezake. Hori balitz kasu honetan Beso edo antzeko zerbait izan genezake, baina datu gehiago beharko genuke zerbait ganoraz ondorioztatzeko. Kasu honetan* goiko aldekoa *dela esaten digu, baina interesgarria da hori esateko euskaldunek ditugun eta eduki ditugun bideak, esaterako* Besoita gonengua*.*

# Besoitaetxebarria (-a) etxebizitza

Aldaerak: Gonengoetxebarri
Ahozkoa:



*43° 11' 19"* *2° 34' 30"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

XX. mendearen hasieran, 1903 inguruan, eraikitako bizitza bakarreko baserria dugu. Besoita inguruan eraikitako azken baserria izateak eman dio izena. Auzotarren artean, *Gonengoetxebarri* moduan ezagutu izan da.

Baserri neoklasikoa da, XIX. mendean nagusitu zen goranzko tendentzia bistan duena. Fatxadetan bi bolumen dira inportanteak: batak sarrera dauka eta bietan soilena da, eta besteak bailarara ematen du. Lehen gorputza hiru ardatzetan antolatuta dago, oso modu sinplean. Erdian atea dauka, eta alboetan, leiho bana. Goiko solairuan eskema bera errepikatzen da leihoetan. Ganbaran, berriz, izkinetan leiho txikiak zabaldu zizkioten. Erdian, inskripzioa jartzeko plaka bat dauka, *Arangurenetxebarria* etxearen bezalakoa, baina hutsik utzi zuten.

Beste fatxadaren ezaugarririk nabarmenena lehenengo solairuan alderik alde doan balkoi luzea da, teilatuaren hegalari paraleloan. Hamaika harrizko mentsulek eusten diote, material bereko zorua dauka, eta burdinazko karela. Bertara zabaltzen dira leiho luze bi, plakadun moldura dutenak ertzetan, eta beste txikiago bat erdian, leihoburua zerbait gorago izanik. Beheko baoek antolamendu berdina daukate. Kantaletan eta bao guztietan, harlandu bikaina erabili zuten. XIX. mendearen erdialdeko baserria da, eta erlazio estilistiko zuzena dauka *Arangurenetxebarria* (**Ikus Arangurenetxebarria**) baserriarekin (1851n eraikia).

## toponimia

*Berrizen badira* -ita *amaiera duten leku izen asko eta* Etxeita *kasuan hasieran etxe egon daitekeela pentsa daitekeen arren beste batzuetan hasierako osagaia pertsona izen bat izan litekeela pentsa genezake. Hori balitz kasu honetan* Beso *edo antzeko zerbait izan genezake, baina datu gehiago beharko genuke zerbait ganoraz ondorioztatzeko. Kasu honetan Besoita auzoko etxe berria da. Deigarria da holakoetan batzuetan* barri *gehitzea eta beste batzuetan, berriz,* etxebarri.



# Besoitaiturria (-a) etxebizitza

Aldaerak: Iturri
Ahozkoa: Ítturri / Iturrikóa

*"... la casería Besoita-iturria... se halla situada en el barrio ó Cofradía de San Lorenzo de la Anteiglesia de Berriz... mide su planta ciento noventa y dos metros cuadrados..."*
*FA / Eskriturak*



*43° 11' 24"* *2° 34' 25"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Baserri honen gainean topatutako lehen arrasto dokumentala 1818koa da, hots, *Besoita Yturria* (1818, BAHP, A341/13. or.). Dokumentazioan beti izen bera topatzen dugu, aldaera gutxirekin. Aldaketa nagusia *iturria* idazteko modua da: *i* latinoaz batzuetan eta y grekoaz besteetan. *Done Laurendi* (**Ikus Done Laurendi**) ermitatik ezkerretara kokatzen den etxe multzoaren parte bat da, eta beste guztiekin batera, *Besoita* auzunea sortzen du. Auzotarren artean ere, *Iturri* moduan ezagutzen da, ahozko formarik erabilienak *Ítturri* edo *Iturrikóa* izanik.

XX. mendean aldaketa batzuk egin zituzten baserrian, leiho berriak zabaldu, hormigoizko balkoi luzea gehitu eta erdialde guztia luzitu. Baina jatorrizko baserria zaharragoa da. Atarteko arkuaren arabera XVIII. mende amaierakoa izan badaiteke ere, ezkerraldeko leihoaren hegiko moldurak pare bat mende zaharragoa dirudi. Edozelan ere, etxea hiru gorputzetan antolatuta zegoen, ardatza atarteko arku bikaina izanik. Zaharrena ezkerraldekoa da eta zituen jatorrizko leihoak ere harlandu ederraz eginda zeuden, bai behekoa, bai goikoa ere, beranduago zabaldu eta desitxuratu zutena. Eskuma aldean, ostera, bestearekin parekatu daitekeena beheko solairua da, kalitatezko harriaz egindakoa hau ere, hormetan, harlangaitza eta kantaletan, harlandua. Gainekoa egurrezko egituraduna da, gaur egun ere oraindik sumatu daitekeena. Teilatua bi isuritakoa dauka.

toponimia

*Berrizen badira* -ita *amaiera duten leku izen asko eta* Etxeita *kasuan hasieran* etxe *egon daitekeela pentsa daitekeen arren beste batzuetan hasierako osagaia pertsona izen bat izan litekeela pentsa genezake. Hori balitz kasu honetan* Beso *edo antzeko zerbait izan genezake, baina datu gehiago beharko genuke zerbait ganoraz ondorioztatzeko. Kasu honetan izenaren bigarren osagaiak hain beharrezkoa den iturriarekin dago lotuta. Etxean horman dagoen txorrota ireketzea besterik egiten ez duenak ezin du imajinatu zein lan handia zen ura etxera eroatea, bereziki hotz edo euria egiten zuenean. Horregatik oso beharrezkoak ziren iturriak eta ahal dela ondoan eraiki behar ziren etxeak.*

# Besoitaormaetxea (-a) etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa:


*43° 11' 20" 2° 34' 28" Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*"... la casería rústica titulada Besoita Ormaechea... situada en la barriada de San Lorenzo jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende con su orrio horno colmenar y basurero ciento noventa y dos estados cuadrados superficiales de area..." DJE 1/160 or. (1864)*

Bizitza biko baserri honen gaineko lehen arrasto dokumentala Bizkaiko su-erroldetan topatzen dugu, 1704. urtean, alegia: *Ormaechea*. Gerora, dokumentu guztietan izen bi topatzen ditugu, hots, batzuetan *Besoitaormechea* (1825, PE/1825) eta beste batzuetan *Ormaechea* (1863, DJE, 1/6. or. / 1967, BUA, CE.). Berriztarren artean ere, izen bi mantendu dira ahozko erabileran, *Ormaétxe* eta *Besóitte ormétxe*, hain zuzen ere.

Oso hondatuta dagoen baserria da, benetan berezia. Bere izenak adierazi moduan, gure ustea zuzena bada, behintzat, hormadun etxea da, harrizko hormaduna, harlanduzko hormaduna. Silarri bikainekoak dira bere osteko horma osoa (saieterak eta puntu erdiko arkudun leihoa dauzka hor) eta fatxada nagusian bereizten diren albo bietako gorputzak, bereziki eskuma aldekoa, oso-osorik harlanduzkoa eta leiho molduratua daukana. Ezkerraldekoak, berriz, kantalak eta leiho inguruak dauzka halakoak. Etxea hiru gorputzduna da, sarri ematen den taxuketa Berrizko baserrigintzan, eta erdiko gorputza material apalagoez eginda dago, besteak baino barrurago. Sarrera gisa atartea dauka, egurrezko dintelduna, eta erdian koloma toskanarra daukana euskarri moduan. Eta gainean, egurrezko egitura, harlangaitzezko tarteekin. Leihoak eta txori-tokiak dauzka goialde horretan, bi isuritako teilatuaren babesean. XVI. mende erdialdeko etxea da, eta barruko zutoinek frogatzen dute dolare batenak zirela.

## toponimia

*Berrizen badira* -ita *amaiera duten leku izen asko eta* Etxeita *kasuan hasieran* etxe *egon daitekeela pentsa daitekeen arren beste batzuetan hasierako osagaia pertsona izen bat izan litekeela pentsa genezake. Hori balitz kasu honetan* Beso *edo antzeko zerbait izan genezake, baina datu gehiago beharko genuke zerbait ganoraz ondorioztatzeko. Kasu honetan izenaren bigarren osagaiak eraikinaren materialekin eralzionatuta dago. Antzina etxeen hormak zurezkoak ziren, oholez eginak, eta horregatik ormaetxea hau "harrizko hormak dituen etxea" da.*



# Besoitaorue etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa:

*"... la casería de Besoita-Orue en el barrio de San Lorenzo de la anteiglesia de Berriz... es de dos viviendas compuestas en el piso bajo de portalada, cocina, cuarto y cuadras, y en el principal de cuartos, camarotes y pajares, ocupa con el horno, tejabana, zaguan [y pertenecidos]... una superficie de cuatrocientos novent y ocho estados, equivalentes a diez y ocho areas y noventa y cinco centiareas..." DJE, 5/208. or. (1886)*



*43° 11' 21"* *2° 34' 26"* *Berriz Irudītan / J.A. Ramos*

Besoita auzunera sartzean aurkitzen dugun lehen baserri honen gaineko lehen aipuak XIX. mende hasieran aurkitzen ditugu: *Besoita Orue* (1826, BAHP, A294/15. or.). Dokumentazioan aldaera gutxi izan du, eta gaur egunera arte, forma bera mantendu da, eta *Besoita-orue* (1886, DJE, 5/ 208. or.) edo *Besoita Orue* (1910, BUA, RU) ditugu horren adibide. Auzotarren artean, *Orue* moduan ezagutzen da baserria, *Órue*, *Orúe* eta *Besóite orúe* izanik ahoz formarik erabilienak.

XX. mende amaieran sute batek hondatu zuen bizitza biko baserria eta, ondoren, eraberritze sakona jaso du, materialak aldatuz, harria bistaratuz eta bao berriak zabalduz, lehenengo solairuko balkoia barne. Gaur egun etxearen ia gehienak harria bistan du, estalita egongo zena bere garaian. Sarritan ikusten ditugun hiru gorputzak ditu, harrizkoak alboetakoak eta dinteldun atartea erdikoan, obren ostean, hormigoizko euskarriaren gainean. Goiko pisuan eta ganbara aldean, ostera, hormak luzituta eta margotuta daude. Bi isurkitako teilatua dauka eta alboetan, horma bana erantsita.

toponimia

*Berrizen badira* -ita *amaiera duten leku izen asko eta* Etxeita *kasuan hasieran* etxe *egon daitekeela pentsa daitekeen arren beste batzuetan hasierako osagaia pertsona izen bat izan litekeela pentsa genezake. Hori balitz kasu honetan* Beso *edo antzeko zerbait izan genezake, baina datu gehiago beharko genuke zerbait ganoraz ondorioztatzeko. Kasu honetan izenaren bigarren osagaia,* Orube, *hitzaren esangura 'solar' da.*

# Betzuen *etxebizitza*

Aldaerak:
Ahozkoa:



43° 11' 59" 2° 34' 19" Berriz Irudita n / J.A. Ramos

*"... la casería titulada de Besuen y sus pertenecidos radicantes en jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz... en la Cofradía o Barriada de San Lorenzo que es de dos viviendas compuesta en el piso bajo de cocina, cuartos dormitorios y cuada, y su habitación superior de cuartos, desban y pajares... ocupa con inclusión del horno y antusano ciento treinta y cinco estados que hacen tres áreas y catorce centiáreas..."*
*DJE, 3/ 197. or. (1877)*

*Oiz* mendian aurkitzen diren hiru etxeak kenduta, Berrizko baserririk garaiena da honako hau, kokapenari dagokionez. Bizkaiko su-erroldetan dokumentatzen da lehenengo aldiz, hots, *Besuen* (1704) eta *Vezuen* (1745). Izenak ia ez du aldaketarik jasan, eta mendeetan ia forma bera mantendu du: *Besuen* (1825, PE/1825), *Besúen* (1859, BUA, Nmcr) eta *Bexuen* (1905, BUA, 40. or.). 1967ko Udal-erroldan *Betzuen* (BUA, CE) forma agertzen da, eta gaur egun, forma horixe bera da normalizatua izan dena. Dena den, berriztarren artean, *Bétzuen* da ahozko formarik erabiliena.

Bizitza biko baserria da, eta fatxadan ere antzematen da hori. Edozelan ere, sarrerako atea erdi ezkutuan dago, etxearen aurrean hormaz inguratutako aterpea egin ziotelako. Isurki biko teilatuaren azpian solairu bi eta ganbara daude. Harlangaitza erabili zuten jasotzeko, nahiz eta kantaletan harlandu bikaina eduki. Bao guztiek, ateak barne, egurrezko dintelak dituzte. Bitxia da iparraldean daukan begiratoki modukoa. 1800. urte inguruko etxea izan daiteke.

## toponimia

*Izen ilun eta deigarria* Lasuen *antzera (***Ikus Lasuen***) ulertzen ez duguna. Pentsa liteke amaieran gune hitza dagoela, baina horrek ez du gainerako guztia argitzen. Gaztelaniaz ez dagoenez z soinua iudikatzeko ikurrik* Besuen *moduan ageri da. Hori eta ahoz* Betzuen *dela kontuan hartzen badugu pentsa genezake benetako izena* **Betsuen** *zela Bizkaian aspaldian galdu baitzen* ts *soinua eta* tz *bihurtu,* sa(r)atza *(saratsa) kasuan bezala.*



# Bidazpia (-a)

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Bidáxpi



*43° 10' 53"* *2° 34' 30"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Bere momentuan, *Abaitua* (**Ikus Abaitua**) inguruan eraikitako etxerik berriena izan zen honako hau, antzinatik datozen baserriak kontuan izan gabe, noski, eta bidearen kontra egindako etxebizitza honek hortik hartzen du izena. Dokumentazioari dagokionez, *Bidazpi* (BUA, CE) moduan dokumentatzen da 1967an Udalak egindako eraikin-erroldan. Auzotarren artean, *Bidáxpi* da ahozko formarik erabiliena.

XX. mende hasierako txaleta da, pintoreskotzat har daitekeena. L itxurako oinplanoa hartzen du, eta fatxada nagusia kalera ematen duena da. Beheko solairua harrizkoa dauka, silarri traketsekin hornituta. Sarrerako atea, alderik estuenean dago, eta arku erakoa da; leihoek, aldiz, dobeladun dintela dute. Lehenengo solairua, ostera, luzituta eta margotuta dago, baoen leihoburuek harrizko moldura badute ere. Ganbaran kantalak harlanduzkoak dira, frontalak egurrezko egitura imitatuz burutu zituzten, eta tartean adreiluak erabilita. Oso etxe koloretsua da.

toponimia

*Izenak berak dioen bezala bidearen azpiko inguruan eraiki zen etxe hau. Eraiki zutenean, zorionez, eta eraiki zutenak txalotu behar ditugu, izen berri eta farregarri bat asmatu beharrean euskal toponimo egoki batez izendatu zuten, geure tradizioari jarraiki.*

# Bidebarrieta

etxebizitza

Aldaerak: Zapateruena
Ahozkoa: Bidebarriéta / Sapáteruena



*43° 10' 51"* *2° 34' 34"* *Berriz Irudítan / J.A. Ramos*

*"... la casería rústica titulada Videaurreta... situada en jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz,... y comprende treinta y tres estados equivalentes a ciento veinte y seis metros cuadrados de planta solar, y la que se compone de piso llano con taller y cuadras, de piso principal, con sala, tres cuartos y cocina, y el resto desban..."*
*DJE, 2/ 108. or. (1867)*

*"... la casería titulada Bidebarrieta, en jurisdicción de Berriz, ocupa treinta y un estados: el zaguan de en frente a la casa trece estados: el terreno abierto que situa al oeste de la casa mide trece estados y nueve pies..."*
*DJE, 7/ 125. or. (1903)*

1785. urtean eginiko baserri-etxe honen gainean dugun lehen aipua mende amaieran aurkitzen dugu, *Bidebarrieta* (1795, BAHP, A46/7. or.). XVIII. mende horretako Bizkaiko azken su-erroldan ere *Videbarrieta* (1796) aurkitzen dugu. Aldaketa gutxi jasan ditu izenak mendeetan zehar, *B* edo *V* idaztean aurkitzen direlarik: *Bidebarrieta* (1825, PE/1825), *Videbarriéta* (1859, BUA, Nmcr) edo *Bidebarrieta* (1910, BUA, RU). Auzotarren artean, *Bidebarriéta* edota *Sapáteruena* dira ahozko formarik erabilienak, azken hori bertako maizterraren ogibidearekin erlazionatuta.

toponimia

*Itxuraz oso gardena den izen honek bi esangura, antzeko baina bi, izan ditzake: "bide berria" edo "bide berriak". Kontua da* -eta *atzizkiak bi esanahi dituela "lekua" eta "ugaritasuna". Bilbon esaterako* Bidebarrieta *izen du kale batek.*





*Bidebarrieta etxearen atzealdea / Berriz Iruditan*

XVIII. mende amaierako baserri-etxea, hurrengo mendean hedatu zen tankeran egina. Bi solairu eta ganbara ditu, isurki biko teilatuaren azpian, eta haren hegal zabalari eusteko, zurezko habeak. Etxeko atea erdian kokatua dauka, eta alboetan, leiho bana. Goiko pisuetan behekoekin lerrokatuta ikusiko ditugu beste bi leiho. Lehenengo solairukoek hegi molduratua dute, eta ganbarakoak txikiagoak dira. Harlangaitza erabili zuten etxea jasotzeko, eta oso harlandu ona, berriz, kantaletan eta bao guztietan. Ateburuan inskripzio informatiboa dauka, eta horren gainean, baliteke beste nonbaitetik hartutako dobeladun dintela. Kristoren eta Mariaren anagramak dituen ezkutua erdian dela, inskripzioak honela dio: *"AÑO DE 1785 / ESTA CASA DE BIDEBARIETA / FUNDO MANUEL DE AGUIRRE"*.





# Bixona

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa:



*43° 10' 48"* *2° 34' 37"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

XX. mende amaieran eraikitako txaleta dugu hau, L itxurako oinplanokoa. Bi solairuz eta teilatupeaz osatuta dago, eta azken hori behekoak baino handiagoa da, teilatuaren hegalari zegokiona etxeari eman diotelako. Angeluan sarrera eta eskaileraren kaxarako beste gorputz bat erantsi diote, teilatupeko solairuaren balkoia zabalduz. Leiho zabalak ditu, horma luzituak eta tarteka azulejoak eta adreiluzko plaka moduko batzuk ditu, material desberdinen arteko jokoa eginaz.

toponimia

*Izen berria jabe bi dituela adierazten duena.*



# Bizkargan

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Bixkargán / Bixkárgan



*43°10'47"* *2°34'34"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

XX. mende hasieran eraikitako etxea da, *Bidebarrieta* (**Ikus Bidebarrieta**) baserriaren inguruan. Hasieratik izen berarekin dokumentatzen da, *Bizcargan* (1967, BUA, CE), hain zuzen ere, eta berriztarren artean, *Bixkargán* edo *Bixkárgan* dira ahozko formarik erabilienak.

Solairu bi eta ganbaradun txaleta da eta simetria ardatz garbiaren arabera antolatuta dauka fatxada nagusia. Behekoan, erdian, sarrerako atea du eta atearen gainean, adreiluzko begiratokia; ganbaran, ostera, balkoi ederra. Beheko eta lehenengo pisuetako aldamenetan, leiho bana. Material desberdinen jokoaz baliatu ziren fatxadari bizitasuna emateko. Horrela, behekoan harria da nagusi eta baoen ertzak egiteko, moldura zapal pintatua. Goian, harlandua kantaletan soilik ikus daiteke eta hormak luzitua ageri dira. Eta gorengoan, adreilua eta zuraje tradizionala imitatzen da.

toponimia

*Etxearen kokapena adierazten duen izena, euskal tradizioari jarraiki sortua. Toponimian, euskaraz eta inguruko hizkuntzetan, ohikoa da gorputzaren zatiak erabiltzea lekuak izendatzeko eta guztietan erabilienak* buru *eta* bizkar *dira. Bigarren osagaia inguruan erabiltzen den* gan *dugu. Garain, esaterako, Oiz mendiaren beste aldean bizi direnei* ganostarrak *esaten zaie (gan+oste).*

# Deskarga

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa:



43° 11' 4" 2° 33' 53" Berriz Iruditan / J.A. Ramos

*"... la casería rústica titulada Descarga... situada en jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende con su antusano sesenta estados equivalentes a doscientos veinte y ocho metros cuadrados de planta solar... y la que se compone de piso llano, con zaguan, cocina aposento y cuadras, y de piso principal con cuartos, dos desbanes y pajar..." DJE 2/133 or. (1864)*

Azken mendera arte ez dugu etxe honen berririk udal-erroldetan. 1867. urtera arte Berrizen kokatuta dagoen *Mertzedarien komentuaren* (**Ikus Mertzedariak**) jabetza izan zelako:

*"… hallándose en posesión de la insinuada caseria de Descarga y sus pertenecidos, la Comunidad de religiosas del Convento de la Anteiglesia de Berriz desde tiempo inmemorial…"*

*DJE 2/134 or. (1864)*

Zeharo eraberrituta badago ere, XVIII. mendeko baserria da. Eraikina sinplea da, harlangaitzaz jasoa, eta harlandu ederra daukana kantal guztietan eta leihoetan, leiho gutxi alajaina. Zurezko dintela duen atartea alde batean du, eta horren gainean, Mesedetako mojen armarria dago, 1765eko datarekin. Bi isurkiko teilatua dauka, eta pisu bi eta ganbara.

toponimia

*Mendateetan oso arrunta den toponimoa dugu. Antzina gauza garraiatzeko mandoak erabiltzen ziren indartsuak izanda ere arinak zirelako, baina mendateetan arazoak zituzten zamatuta igotzeko eta aldatsa hasten zen lekuan zama apur bat kentzeko lekua egoten zen. Zama hori beste gurdi eta mando-taldera pasatzen zen eta gora heltzean berriro zamatzen ziren jatorrizko mandoak. Idien kasuetan ohikoagoa zen aurrean beste bikote bat jartzea.*



# Done Joanes Ebanjelaria eliza

Aldaerak: San Juan Ebangelaria
Ahozkoa:



*43°10'30" 2°34'37" Barriz Iruditan / J. A. Ramos*

Joanes apostolua eta ebanjelaria izan zen. Margoetan sarri ageri da Azken Afarian Jesusen ondoan, baina beste ebanjelariekin batera ageri denean arranoaren itxura hartzen du.

Trentoko kontzilioak ekarri zuen santuen euskarazko izenak baztertzea eta erdarazkoak nagusitzea horregatik Bizkaian ohikoa izan da jatorrizko *Joan* (*Yoan* ahozkatua) izenaren ordez euskaraz ere gaztelaniazko *Juan* (gaztelaniazko jota-rekin) erabiltzea. Horretaz gain euskaraz badira era asko santu hau deitzeko, arrunteenak *Joanes* eta bere txikigarria den *Manex* ziren, baina ezbairik gabe Sabino Aranak asmatutako *Jon* da erabiliena.

Gaur egungo eliza XVI. mendearen erdialdekoa da, Errenazimendukoa, hain zuzen ere. Dena dela, beranduago egindako presbiterioa eta kanpandorre barrokoak ditu, oinaldean. Argia emateko, puntu-erdiko arkudun leihoak zabaldu zituzten hegoaldera begira. Lau ataletan antolatzen da, eta garai hartan Euskal Herrian ohikoak diren gurutze-gangak ditu estalki. Oinaldeko korua ere ederra da. Harlandu bikainaz egin zuten, eta, inguruko beste elizak legez, aterpea edo elizpea du kanpandorreareen azpian, zokalo eta koloma klasikoen gainean eutsita.

# Done Laurendi ermita

Aldaerak: San Lorentzo
Ahozkoa:



*43°11'7"* *2°34'21"* *Berriz Iruditan / A. Arbulu*

San Lorentzo edo euskaraz Done Laurendi Erromako diakonotako bat izan zen eta 258an urtean martirizatu zuten parrillan erreta. Tradizioaren arabera Iberiar penintsulan jaio zen. Kondairak dioenez erretzen ari zela esan zuen: *Assum est, inqüit, versa et manduca* ('erreta nago, eman buelta eta jan'). Oso santu zaharra da eta bere jaiera edo debozioa oso zaharra da kristauen artean. Jai eguna abuztaren hamarrean da.

Trentoko kontzilioak ekarri zuen santuen euskarazko izenak baztertzea eta erdarazkoak nagusitzea. Horregatik Bizkaian ohikoa izan da jatorrizko Laurendi izenaren ordez euskaraz ere gaztelaniazko Lorentzo erabiltzea euskal fonetikara makurtuta. Berriz, inguruko herri guztietan bezala Sallobente erabiltzen da euskaraz. Hau gaztelera zaharreko San Llorente-ren euskerazko aldaera da. Izenak esangura galdu zuenez XX. mendean Mañarian harrobi bat eraikitzean izena ez zuten ulertu eta Sallobente jarri beharrean Zallo Venta izendatu zuten.

Mendibilen dago auzoari izena ematen dion ermita hau. Atal bakarraz osatuta dago, forma luzanga duena. *Done Petri Txiki* (**Ikus Done Petri Txiki**) ermitaren moduan, elizpea oinaldean dauka, eta, iparraldeko haizeetatik babesteko, horma luzatu diote. Haatik, bestean ez bezala, elizpeko teilatuari eusteko koloma klasiko moztuak erabili dituzte, zokaloaren gainean eutsita. Sarrera bertan dago, eta, hormaren ordez, zurezko hesia du barrualdea ikusi ahal izateko. Oso harlandu onaz egindako eraikina da. Alboko fatxadan dauka kanpai-horma klasizista, harlanduzkoa hori ere eta pinakuluekin eta bolekin azkendua.



# Elexaoste

etxebizitza

Aldaerak: Giputxena / Errota
Ahozkoa: Erróta / Errótie / Kipútxena / Pildáiñena

*"... la casería rústica titulada Elejaoste... situada en la Cofradía o barriada de San Lorenzo jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende ciento setenta y ocho estados, equivalentes a seiscientos setenta y siete metros cuadrados superficiales de cabida... y la que es de dos viviendas, que se componen de pisos bajo y alto a manera de entresuelo..."*
*DJE, 1/ 232. or. (1866)*



*43°10'31"* *2°34'41"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*Oka* errekaren urak aprobetxatzen duen errota honen gaineko lehen aipamena aurkitzen dugu XIX. mendearen bigarren erdian, hots, *Elejaoste* (1866, DJE, 1/ 232. or.). Aldaera gutxi ezagutu dituen eraikina da honako hau: *Elexaoste* (1873, DJE, 3/ 85. or.) edota *Elejoste* (1967, BUA, CE). Egun, hiru bizitzatan banatuta dagoen errota izandako eraikin hau, eta auzotarren artean, izen desberdinekin ezagutzen da. Batetik, *Erróta* edo *Errótie* eraikinaren erabilerarekin lotuta dagoen forma dugu, eta, bestetik, *Kipútxena* edo *Pildáiñena*, jabeen goitizenarekin eta abizenekin erlazionatuta daude azken horiek.

Izenak garbi dioen moduan, eliza osteko errota izandako etxea da. Guztiz eraldatuta dago, etxe bizitzatan antolatua eta gaur egungo bizimodura egokitzeko. Eta itxura batean, behin-tzat, ez zaio antzematen sasoi bateko izaera industriala. Luzenka izateak eta etxearen gailurra fatxadaren paraleloa izateak XIX. mendean, behintzat, eratutako etxe baten aurrean gaudela diosku. Hala, pisu bi eta ganbaradun etxebizitzak dira. Behean, sarrerako atea, garajea eta leihoak dituzte. Lehenengo pisuan, leihoak eta balkoiak. Eta gorengoan, ganbarako leihotxoak. Harlangaitzaz eraikitakoa da eta gaur egun bistan badauka ere, luzituta eta zurituta egongo zen, alde bateko goi partean ikusten den moduan.

toponimia

*Latineko grezierazko jatorria duen latineko* ecclesa *hitzetik sortu ziren* iglesia *gaztelaniaz eta* eliza *euskaraz. Hitzaren grezierazko esanahia 'batzarra' da. Baina euskara zaharrean* eleiza *zen, handik sortu ziren mendebaldeko* elexa *eta beste euskalkietan erabiltzen den* eliza*. Dena dela, XX. mendean* eleiza *aldaera nagusitu zen Bizkaian jatorrizko* elexa *baztertuz. Beraz, elizaren atzeko etxea dugu hau.*

# Elizgain

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa:



*43°10'31"* *2°34'41"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

XX. mende erdialdean egindako etxea dugu honako hau, *Ganekoetxea* eta *Done Joanes Ebanjelariaren* elizaren inguruan.

1953an egindako baserria da, gaur landa-izaera galdu badu ere. Bi pisu eta ganbara ditu, isurki biko teilatuaren babesean. Baoen antolamendua oso simetrikoa da, ardatza indartuz. Horrela, atea erdian dauka, eta gainean, balkoia. Alboetan, leiho bana dauka bi solairuetan, eta ganbaran, leiho txiki bi ditu elkarren ondoan. Hormak luzituta eta margotuta dauzka; kantalak eta beheko pisuko bao guztiak, ostera, harrizko plakekin hornituta.

toponimia

*Elizaren goiko aldean dagoen etxea. Izen berria da Bizkaieraz* elexa *izan baita hitza, azken urteotan* eleiza *erabiltzen hasi bada ere. Horregatik Bizkaian oso arruntak dira* Elexalde *edo* Elexaoste *(***Ikus Elexaoste***) moduko izenak. Kasu honetan euskara estandarreko eliz(a) hitza dugu. Hau gutxi balitz ekialdeko gain du, inguruan gan erabiltzen baita.*



# Erdikoetxea (-a) etxebizitza

Aldaerak: Landetxea
Ahozkoa:

*"... la casa titulada Erdico-echea, sin numeración, en jurisdicción de Berriz, que consta de dos habitaciones y dos camarotes: la primera habitación se compone de carrejo, cocina, un dormitorio, sala con dos alcobas y retrete: y la seguda habitación tiene carrejo, cocina, cinco dormitorios, galería y retrete: ocupa una planta solar de trece metros de largo con ocho metros de ancho, lindante... al Norte con la casa posada de Bidecurutzeta..."*
*DJE 8/227 or. (1907)*



*43° 10' 54" 2° 34' 29"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*Abaitua* inguruan aurkitzen dugun baserrietxea dugu honako hau, antza garai batean arostegia izandakoa. *Abaitubidekurutzeta* (**Ikus Abaitubidekurutzeta**) baserriarekin lotura zuzena izango duena, dena den, eta alboko baserriekin gertatzen den ez bezala, honen inguruko aipuak ez ditugu lortu, XX. mende hasierakoak izan ezik, *Erdico-echea* (1907, DJE). Auzotarrek *Karterokua* moduan identifikatzen dute, eta azken urte hauetan duen aktibitateaz ere, *Landetxea*.

Etxe berria dugu, pisu bi baino ez ditu, eta oso era sinplean antolatutako fatxada. Bietan baoak hiru badira ere, ez daude lerrokatuta, behekoak zabalagoak direlako. Atea alde batean dauka, aterpe txiki baten babesean. Gaineko baoak leihoak dira, eta behekoak harlanduz inguratuta daude. Goikoak, ostera, egurrez hornituta ditu, eta tartean adreiluzko hormak zabaldu dituzte, tradiziozko zura-egiturarekin eraiki baitute, baita frontoian ere, txori-toki eta guzti. Horretan izan ezik, hormak kalitate oneko harlangaitzaz jaso dituzte, izkinetako harlandu argiagoaz kontrastea eginez. Fatxadan dagoen inskripzioak honela dio: *"ERDIKOETXE / JOSE Mª GUERENABARRENA–Mª ITZIAR EGAÑA / 2003"*.

toponimia

*Bestelakoa azalpenik behar ez duen izena. Izen berria da Bizkaiko toponimian holakoetan Arteko ageri baita.*





# Errementaria (-a) etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa:



43° 10' 49" 2° 34' 38" Berriz Iruditan / J.A. Ramos

*Batarritaetxebarria* (**Ikus Batarritaetxebarria**) baserriaren ondoko eraikina da hau, eta jabeak lan egiteko erabiltzen zuen eremua. 1930.urte inguruan, eraikinari goiko pisua gehitu zitzaion, eta hortik aurrera, lehengo erabilerarekin lotutako izena hartu zuen: *Errementari*. Horrela ezagutzen da egun Berrizen berriztatua izan den etxe hau.

Horrez gain, esan behar 1936an Berrizko batzokiaren egoitza izan zela.

*Batarritaetxebarri* etxeko jabearen lantoki izan ei zen, eta eraikin biak ondo-ondoan daude, elkarren segidan. Oraintsu berriztatu dute, eta harria desestali eta bolumena handitu diote. Hala ere, etxearen egitura sinplea da, eta fatxada nagusia kalera ematen duena da, teilatuaren gailurrarekin paraleloan doala. Bi pisu eta ganbara dauzka, eta baoak hiru ardatzetan antolatuta, ganbaran izan ezik, bakarra dauka eta.

toponimia

*Gaur egun auto tailerrak bezala garai batean herri guztietan egoten zen errementari bat bai tresnak egin edo konpontzeko, baita abereak ferratzeko ere.*



# Etxaburu

etxebizitza

Aldaerak: Trokotxena
Ahozkoa: Etxáburu / Trokótxena

*"... la casería rústica titulada Echaburu...situada en el barrio de San Lorenzo jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende con su antusano mil setecientos sesenta pies cuadrados de planta solar, la que se compone de piso bajo con su zaguan, cuarto y cuadras, y de piso principal con cocina, tres cuartos y pajar... "*
*DJE 2/41 or. (1866)*



*43° 10' 52"* *2° 34' 34"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Bizitza bakarreko baserri arrastoa Bizkaiko su-erroldetan topatzen dugu, 1745. urtean, eta bertan Sallobente-Mendibil kofradiaren baitan zegoen baserri bati erreferentzia egiten zaio, hots, *Echaburu*. Hortik aurrera, forma bera mantendu da dokumentu guztietan. Auzotarren artean, *Etxáburu* edo *Trokótxena* dira ahozko formarik erabilienak.

Eraberritze sakona jasan duen baserria da, errotik aldatu dena. Azkeneko berrikuntzan hormen tratamenduan desestalitako harria eta luzitutakoa konbinatu dituzte. Horregatik antzeman daitezke etxeak izan dituen handitzeak eta leihoak zabaltzeko aldi desberdinak ere: batzuk harlanduzkoak, beste batzuk egurrezko dintela daukaten edo zarpiatuak diren bitartean. Etxearen sarreretan ere antzeko diferentziak nabarmentzen dira. Edozelan ere, fatxada nagusia bi isurkiko teilatuak sortzen du, eta oso sinplea zen, gaur egun ganbaran bi leiho luze baditu ere. Atartea aldamenean dauka, eta ondoan, leiho bakarra; lehenengo solairuan bi leiho ditu, beheko baoekin lerrokatuta. XVIII. mendeko baserrien traza gordetzen du oraindik.

toponimia

*Izen honek dituen osagaiak argi eta gardenak dira,* etxe, *hitz konposatu zaharretan* etxa *bihurtzen zena eta* buru, *"gain" adierarekin. Euskal fonetikaren lege baten arabera hitz konposatuetan bi silaba duten hitzek -a hartzen dute amaieran eta, esaterako,* baso *eta* pago *konposatuetan* basa *eta* paga *bihurtzen dira (*basakatua, pagadia*).* Etxe *izenarekin gauza bera gertatzen zen eta* etxa-ra *aldatu, baina oso izen gardena denez arrunta da geroago berriro* etxe *bihurtzea eta, esaterako Elorrioko San Agustin Etxebarria antzina* Etxabarria *zen.*

# Etxaburuaurrekoa (-a) etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Etxáburu



*"... una casa conocida con el nombre de Echaburuaurre-coa sita con su solar y huerta contigua que le corresponde en el Distrito del Norte y Cofradía de San Lorenzo jurisdicción de Berriz... comprende con su solar y huerta una medida superficial de doscientos seis estados o sean siete areas con ochenta y siete centiareas..."*
*DJE 4/29 or. (1879)*

*43°10'51"* *2°34'33"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Berriz elizateko iparraldeko barrutian (jabego-eskrituretan agertzen den moduan) kokaturik dugu baserri-etxe hau. Erroldetan eraikin honen gaineko aipu gutxi aurkitu ditugu. Baliteke alboan duen *Etxaburu* (**Ikus Etxaburu**) baserriarekin batera agertzea, ahozko formak biltzean ere behin baino gehiagotan etxe hau *Etxáburu* moduan jaso baita.

XIX. mendeko etxea da, hiru solairutan jasoa eta lau isurkiko teilatuduna. Beranduago beste eraikin bat erantsi zioten, eskumaldean, etxe erdi bat balitz moduan. Etxe biak garaiko etxeen antzera eraikita daude, harlangaitzezko hormak luzituta eta pintatuta, eta harlandu ederrekin kantaletan eta bao guztietan. Nagusia oso etxe ordenatua da, erdiko ardatza izanik antolatzaile eta erakargarri. Sarrerako atea erdian dago, zabala oso, eta ateburua dobeladun dintela da. Gainean, leiho luzea du, karel eta guzti. Bi pisuetan, aldamenetan, leiho bana dauka, eta hirugarren pisuan, hiru leiho. Ondokoak eskema berari jarraitzen dio; baina ganbaran leiho bat baino ez dauka, isurki bateko teilatua izanik, forma horri egokituta daukalako fatxada.

## toponimia

*Izen honek dituen osagaiak argi eta gardenak dira,* etxe, *hitz konposatu zaharretan* etxa *bihurtzen zena eta* buru, *"gain" adierarekin. Euskal fonetikaren lege baten arabera hitz konposatuetan bi silaba duten hitzek -a hartzen dute amaieran eta, esaterako,* baso *eta* pago *konposatuetan* basa *eta* paga *bihurtzen dira (*basakatua, pagadia*). Etxe izenarekin gauza bera gertatzen zen eta* etxa-ra *aldatu, baina oso izen gardena denez arrunta da geroago berriro etxe bihurtzea eta, esaterako Elorriko San Agustin Etxebarria antzina* Etxabarria *zen. Izenaren bigarren osagaiak Etxaburu etxearen aurrean egindako etxea dela adierazten du.*



# Etxezuria (-a)

etxebizitza

Aldaerak: Ikastola
Ahozkoa: Etxésuri

*"... la casa rústica titulada Echezuria... situada en la Cofradía o barriada de San Lorenzo jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende sesenta y cinco estados, equivalentes a doscientos cuarenta y siete metros cuadrados superficiales de planta solar... y la que es de dos viviendas, componiéndose de pisos bajo, alto y desban, con sus correspondientes cuadras divisiones y habitaciones..."*
*DJE 1/235 or. (1864)*



*43°10'29"* *2°34'37"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*Elizondo* plazan kokatzen den etxe honen gaineko lehen aipamenak XVIII. mendekoak dira, *Echezuria* (1745, Bizkaiko su-erroldak) eta forma berdina mantendu du hortik aurrera, salbuespen batzuk izan ezik: *Echezuria* (1825, PE), *Echezuria* (1857, BUA, Viv) edo *Echezuri* (1967, BUA, CE). XX. mende hasieran aurkitzen dugu *Echesuri de Elisondo* (1905, BUA, 40. or.) moduan. Herritarren artean, *Etxésuri* da ahozko formarik erabiliena. Eraikinak izan duen azken erabilpenaren ondorioz, batzuk *Ikastolako* etxe moduan ere ezagutzen dute.

Ondoan dagoen *Apaizetxearen* antz handia du urtetan ikastola izandako etxe honek. Izenak luzitutako hormen koloreari egiten dio erreferentzia, nahiz eta gaur egun ez den hain zuri ageri. Horretarako bidea ematen dute, batez ere, beranduago irekitako leiho berriek, harlanduz inguratuta ez daudenak. Etxea, beraz, orain baino ilunagoa zen, zituen baoak neurri onekoak baziren ere.

Hiru solairu eta ganbaradun etxea da eta fatxada nagusian, leihoak kokatzeko ardatzak, jatorrian bi baino ez ziren, hau da, sarrerako ate bien gaineko leiho luzeak, lehenengo solairukoak balkoi bilakatuta daudenak. Batasuna emateko, hauen alboetan leihoak zabaldu zituzten behekoekin lerrokatuta. Eta *apaizetxeak* ez daukana fatxada nagusian, kortako ate ederra alde batean dauka *Etxezuriak*. Eta ostean, XX. mende hasieratik aurrera oso modan egon ziren galeria handia.

toponimia

*Antzina etxeak zurezkoak ziren eta denborarekin zura beltzu egiten da. Geroago harrizko hormak hasi ziren eraikitzen, baina hauek ere ilunak ziren ormak zuritzeko behar zen kolorea lortzeko kare harria erre egin behar baitzen karobietan eta horren ondorioz garestia zen etxe bat zuritzea. Horregatik etxe hau XVIII. mendean zuriz margoztutako bakanetako bat izan behar zen.*

# Fonda

desagertuta

Aldaerak:
Ahozkoa: Fóndie



*Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Berrizko tren geltokitik gertu kokatzen zen taberna-etxea dugu. XX. mendean zehar Berrizko eta berriztarren historien parte izan den taberna. Herrian aurkitzen ziren tabernen artean daukagu hau eta *Fonda* moduan dokumentatzen da. Berriztarrek hamaika bizipenen tokia izan den hau *Fóndie* moduan ezagutzen dute. Egun, leku berean garai berriei egokitutako taberna berria aurkitzen dugu, *Fonda* izena mantendu duena.

Etxe trinkoa zen, pisu bi eta ganbara zituena, eta bertan etxebizitza desberdinak zeuden. Sarrerako atea bereizita zuten, eta aldeetan leihoak zituzten, baita gainean ere, behekoekin lerrokatutakoekin. Hala ere, fatxadetako uniformetasuna hausten zuten balkoiak, begiratoki txiki batek eta atxikitako beste egurrezko begiratokiak. Hormak luzituta zituen.

toponimia

*Azalpenik behar ez duen izena. Hala ere, izen zaharra euskaraz* benta *zen.*



# Foralena

bulegoak

Aldaerak:
Ahozkoa: Foralena

*"... una heredad situada en la anteiglesia de Bérriz, Cofradía de San Lorenzo, que mide setecientos cincuenta metros cuadrados... una casa destinada a Sucursal de la Institución [Caja de Ahorros Vizcaína]... que consta de sótano, planta baja, piso alto y desván..."*
*BUA / Jabego Eskriturak, 1976*



*43°10'32"* *2°34'36"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

XX. mende hasieran altxatutako eraikina dugu honako hau, Bizkaiko Foralen kokalekua izateko. Urtetan Bizkaiko zaindarien Berrizko egoitza izateaz gain, *Caja de Ahorros Vizcainaren* bulegoak hartu zituen. Gerora, XX. mendeko azken urteak Udaletxe zereginak izan zituen, egun duen erabilera izan baino lehen. Orain *Urkiola Landa Garapen* elkarteak bertan du bere egoitza. Dena den, erabilpen desberdinak izan arren, berriztarren artean *Foralena* da ahozko forma erabiliena.

Eraikin bitxia. Izan ere, sasoi bateko estilo artistikoak berreskuratzeko asmoa bistan da bertan eta. Bolumen desberdinak dituen arren, aurreratuta dagoena da etxearen tankera definitzen duena, bere hastial eta guzti. Pisu biz osatuta dago, eta behekoan hiru sarrerako arkuek dute indarra, baita tarteko plakek ere, segurutik bertan zerbait lantzeko prestatuak. Goikoa, ostera, leiho termal batek finkatzen du, baina aurrean egin dioten gorputz molduratu eta pinakuluek erdi ezkutatuan uzten dute. Harria erabili zuten eraikina egiteko, baita sarrerako eskailerak egiteko ere. Hauetan ere bistakoa da estilo historizistaren presentzia, errematen bolek adierazten duen lez.

toponimia

*Gerra Zibilaren ondorioz foruak galdu genituen arte Bizkaiak berezko polizia zuen, Foralak deiturikoak. Foralak 1784an sortu zituen BFAk udaletako polizia laguntzeko eta azkenean 1937an desagertu ziren.*

# Ganekoetxea (-a) etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Gáneketxie / Gáneko




*43°10'31"* *2°34'38"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*"... la casería rústica titulada Ganecoechea... situada en la cofradía o barriada de San Lorenzo jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende con su accesoria cincuenta y seis estados cuadrados superficiales de planta solar, equivalentes a doscientos trece metros cuadrados y la que se compone de piso bajo, alto y desban, con sus correspondientes cuadras, divisiones y habitaciones..." DJE, 1/226. or. (1866)*

Lehen aipatutako *Abeletxe* (**Ikus Abeletxe**) baserriaren ondoan kokatzen den baserria da honako hau. XVIII. mende erdiko Bizkaiko suerroldan dugu honen berri lehenengoz, hots, *Ganecoechea* (1745). Hortik aurrera, ia aldaketarik gabe forma berdina errepikatuko da behin eta berriz, eta *Ganecoechea* (1825, PE/1825) eta *Ganeco Echea* (1905, BUA, 40. or.) ditugu horren isla. Baserri-taberna hau berriztarren artean *Gáneketxie* edo *Gáneko* moduan da ezaguna, horiek izanik ahozko formarik erabilienak.

XVIII. mendeko baserria dugu, oraintsu berriztatua. Bi isurkiko teilatuaren azpian, solairu bi eta ganbara dituen etxea daukagu. Lehenagotik ere hedatuta zegoen eskemaren arabera antolatu zuten fatxada nagusia, hau da, hiru gorputzetan. Beheko solairuaren erdian, atartea dauka, egurrezko dintela zuena, eta alboetan, harlangaitzezko hormekin burututa beste bi gorputz ditu, harlanduzko leiho bana daukatenak.

Harlanduzkoak dira ere etxearen kantalak, sarri izaten den moduan. Goiko pisuak, ostera, egurrezko egitura erabilita burutu zituzten, leihoak tarteko, eta hormak luzituta eta pintatuta daude. Nabarmenena erdian duen balkoiari ezarritako hormigoizko zorua dugu.

toponimia

*Aparteko azalpenik behar ez duen etxe izena goiko aldean dagoen etxea izendatzen baitu.*



# Ganekoetxetxikia (-a) etxebizitza

Aldaerak: Medikuena
Ahozkoa: Médikuana



*43°10'31" 2°34'39" Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

XX. mende hasieran dugu eraikin honen inguruko lehen aipamena, *Ganeco Echechiquia* (1905, BUA, 40). Hortik aurrera idatzizko dokumentuetan modu berean agertzen bada ere, berriztarren artean *Médikuana* moduan ezagutzen da. Antza Berrizko medikuaren etxea izan baitzen.

Aspaldiko txaleta da, bizitza bikoa. Bolumen bi ditu, eta handiak atxikita dauka beste txikiago bat, kale aldeko horma adreiluz forratuta daukana. Eraikin estua da, eta bi solairuz eta ganbaraz osatua dago. Baoak ez dira ugariak eta sarrera-ateen inguruan kokatzen dira. Etxe nagusiaren alderik luzeenean, atea dago, alde batean. Leihoa du gainean, eta aipagarriena ondoko begiratokia da.

Alderik estuenean, ostera, ardatzean kokatzen dira atea, leiho luzea eta ganbarako elkarren ondoko leiho estu biak. Beranduago, beste leiho bat zabaldu zuten sarrera ondoan. Izenak adierazi legez, etxea txikia da, eta tartekako kolore gorriak alaitasuna ematen die baoei eta teilatu-ertzei.

toponimia

Ganekoetxe *ondoan eraikitako etxe txikia izenak berak dioen bezala. Bizkaian oso arrunta da etxe izenak sortzeko ondoko etxearen izenaz baliatzea eta horrek oso izen luzeak sortzen ditu. Jokabide hau zaharra da eta ondorioz oso deitura luzeak sortu dira Bizkaian baserri izenak deituren sorburu baitira.*

# Iturritzaga

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Itúrritza



43°10'47" 2°34'28" Gerediaga Elkartea / T. Angoitia

*"... la casería rústica titulada Yturriozaga... situada en el barrio de San Lorenzo jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende con su antusano y horno tres mil doscientos treinta pies cuadrados superficiales de planta solar, y la que se compone de piso bajo con zaguan, cocina y cuadras, y de piso principal con dos cuartos pajar y desban..."*
*DJE 2/45 or. (1866)*

Komentutik (**Ikus Mertzedariak**) gertu kokatzen den baserri honen gaineko lehen aipamenak XVIII. mendean aurkitzen dira, hots, *Yturrizaga* (1704, Bizkaiko su-erroldak). Dokumentazioan zenbait aldaera jasotzen dira hurrengo mendeetan, besteak beste: *Yturriozaga* (1825, PE/1825), *Yturriaga* (1857, BUA, Viv), *Yturriozaga* (1906, DJE, 7/ 244. or.) eta *Iturriza* (1967) BUA, CE). Auzotarren artean, *Itúrritza* da ahozko formarik erabiliena.

Baserri-etxe bitxia da, eta jatorrizko etxe zaharragoa barruan gordetzen du. Barrukoa oso kalitate oneko harlanduz egin zuten, eta jauregi errenazentista baten itxurako eraikina da. Aitzitik, XVII. mendean landetxe bihurtu zutela dirudi, eta etxe berriagoa egin zuten, gorputz hori inguratuta. Horren fatxada nagusian sarritan ikusten ditugun hiru gorputzak daude.

Beheko solairua harrizkoa da. Hormak harlangaitzezkoak dira, eta harlanduzkoak, berriz, kantalak. Erdian, egurrezko dintelak babestutako atartea dauka. Gainekoa eta teilatupea, berriz, guztiz desberdinak dira. Egurrezko egitura erabilita jaso zituzten bi pisuak, kantaletako izugarrizko tantaiak barne. Hormak adreiluz bete zituzten, eta tarteka, leihoak zabaldu, baita txori-tokiak ere, ganbaran. Horma horiek estuagoak direnez, barrurago daude.

*Lariz* jauregiaren edo dorrearen antzera, gorputz nagusiari atxikita dauka eskailerentzako kuboa. Teilatua bi isurkikoa da. Etxe zaharra XVI. mendekotzat har genezake, eta berria, aldiz, barrokotzat, hurrengo gizaldikoa. Horrela pentsarazten digute barruko koloma batek, leiho baten erlaitzak eta sarrerako atean dagoen belarridun plaka molduratuak.

toponimia

*Izen garden eta Euskal Herrian arrunta Igorren, Zeanurin eta Lazkaon ere badira izen bera duten baserriak. Osagaiak iturri, hitz arrunta, ugaritasuna adierazten duen -tza atzikia eta lekua adierazten duen -aga: "iturriak dauden lekua".*

# Kotxera

etxebizitza

Aldaerak: Cochera de Abajo
Ahozkoa: Ategorridxe



*Berriz Iruditan*

*Cochera de Arribarekin*, egun *Txirriena* (**Ikus Txirriena**) moduan ezagutzen den baserriarekin, guztiz erlazionatutako eraikina. Bata zein bestea *Palazioaren* eraikinak ziren bertako kotxeak, karruak, etabar gordetzeko. Kokapenari erreparatuta, honako hau *Cochera de Abajo* moduan dokumentatua izan da, nahiz eta herritarren artean beti *Kotxera* edo *Ategorridxe* moduan ezagutua izan den. Azken izen hau *Palazioaren* eremura sartzeko zegoen atearen kolorearekin lotu behar da.

Berriztarren jauregiaren lurretan, behealdean, haien zalgurdien gordeleku eta zaldizainen bizitokia zen etxea zegoen. XX. mende hasieran zabaldu zen euskal estilo berrian jaso zen, kokatuta dagoen erripari ondo egokituta. Euskal estilo berriarentzat baserria izan zen inspirazio-bidea, eta hala egin zuten etxe hau.

Fatxada nagusia palazioari begira zegoen eta bertan hiru pisu bereizten ziren. Behekoan, adierazgarria arkudun atartea zen eta bere alboetan leiho bana zabaldu zuten, dintel

toponimia

*Etxe eder honen izena, Kotxera, autoak gordetzeko berezko eginkizunetik datorkio.*



*BUA /Mapa topografikoa, 1933*

kurbatudunak. Lehenengo pisuan, tankera bereko leihoak zeuden, handiagoak, eta ganbaran, galeria moduko bat, zurezko egituraren babesean, baita alde bateko terraza, teilatu eta guzti. Sarrerako arkuaren gainean familiaren harrizko armarria jarri zuten. Baita euskal estilo berriaren adierazgarri izaten ziren solairuak bereizteko zuburuak, eusteko balira moduan, eta tarteko irtenguneak, ezproi gisa, harrizko mentsulen gainean. Materialen nahasketa ere gustuko zuten, eta fatxada luzituak nabarmendu baziren ere, egurra, harria eta adreilua ere erabili zuten, etxe honen ganbara aldean bezala.

# Lariz

etxebizitza

Aldaerak: Palazioa
Ahozkoa: Láix / Léix



43° 11' 21" 2° 34' 16" Berriz Iruditan / J.A. Ramos

*"... la casa principal Torre o Palacio rústico titulado de Lariz... radicante en jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, con su antusano, fronterizo y lateral, y la caseta horno, y que contiene el Placio en su planta solar, cuarenta y dos estados y veinte y seis pies, y se compone de piso principal, zaguán, cuadra y camaron, y su antusano fronterizo y lateral tiene cuarenta y nueve estados y treinta y un pies de cabida, y la caseta horno inmediata, ocho estados y veinte y ocho pies..."*
*DJE 1/6 or. (1863)*

*Palazioa* moduan ezagutzen bada ere, *Lariz* (1796) forma aurkitzen dugu jasota XVIII. mendean Bizkaiko su-erroldetan. XIX. eta XX. mendeetan ere izen bera mantentzen da, 1910eko aipamena salbuespena izanik, urte horretako errolda batean *Torre Palacio de Lariz* moduan jasotzen baita. Izena errotuta dago herrian, eta inguruko etxeekin batera *Lariz* izenez ezagutzen da zonaldea. Berriztarrek *Láix* eta *Léix* formak erabiltzen dituzte ahozkotasunean.

XVI. mendeko landa-jauregia da, oraindik dorretxe izandakoaren itxurarik gordetzen duena. Harriz egindakoa da, eta orduan tipikoak ziren silarriak erabili ziren hormak jasotzeko, baita akabera gisa daukan erlaitza egiteko ere, ez baitu hegaldun teilaturik. Hiru solairutako etxea da, eta, fatxadetan nolabaiteko ordena mantentzen duen arren, baoek edo leihoek ez dute antolamendu garbirik, neurri eta forma desberdinekoak baitira, XVI. mendean oraindik ohikoa zena.

Fatxadan atxikita ditu eskailerentzako kuboa eta komuna ere. Bitxiak dira leiho biribilak eta teilatuko gargola. Hala ere, aipagarriagoak dira balkoia eta armarria, biak manierismoaren adierazgarri. Balkoiak ordena baten intsignia du buruan, eta XVI. amaierako kateen dekorazioa inguruetan.

Sarrera gaineko armarria ere korronte estetiko horretan sartu beharko genuke, bereziki horren marko den dekorazioa eta inskripzioa. Azken horretan goiburu hau irakur daiteke: *"QUIEN . EL CAMPO . BENCIO . I ROMPIO / LA CADENA . PONGA . CORONA . I / ALCE . PENDON . LOBOS I CALDERO"*. Garaiko kalitatezko beste etxeen antzera, lau isurkiko teilatua dauka.

toponimia

*Euskal etxe-izen eta herri-izenetan ageri den iz amaiera beti lotu da jabetzarekin. Badirudi, neurri batean, egungo "-ren" atzizkiaren esangura zuela eta aurrean pertsona izen bat zuela. Tamalez holako izenak zahar-zaharrak dira eta sarritan ez dakigu zein ote zen izen hori.*



# Larizerdikoa (-a) etxebizitza

Aldaerak: Larizbekoa / Larizetxebarria
Ahozkoa: Láix Békue / Békue / Serrie



*43° 11' 23"* *2° 34' 16"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*Lariz* jauregia (**Ikus Lariz**) eta *Larizkoerrota* (**Ikus Larizkoerrota**) artean gelditzen den baserria da honako hau. XIX. mendeko baserri honen gaineko lehen aipamenak XX. mende hasieran aurkitzen ditugu: *Defrente al palacio de Lariz* (1906, DJE, 7/ 248. or.) eta *Lais echevarria* (1910, BUA, RU). Eraikina erre ostean berreraikia izan zen, eta ordutik eduki duen funtzioagatik ezaguna izan da berriztarren artean: *Serrie*. Inguruan duen *Larizgoitia* (**Ikus Larizgoitia**) baserritik bereizteko, behealdean aurkitzen den honako hau *Láix Békue* edo *Békue* moduan ezagutu izan da.

XX. mende erdialdeko etxea, 1941ean erretakoaren ordez jaso zutena. Sasoiko beste asko moduan, etxebizitzatan banatuta dago, hiru pisutan, behekoa garaje eta antzekoetarako utzita, eta sarrerako atea aldamen batean dauka, eskailerak igota. Etxebizitza bien baoak zabaltzeko irizpideak berdinak diren arren, lehenengoan, alde batean, leihoak baino ez daude eta fatxada estuenean, begiratokia da nagusi. Bigarrenean, ostera, bi fatxaden erdikoan balkoiak ireki zituzten. Isuri biko teilatudun etxea da eta hormak luzituta dauzka.

toponimia

*Bizkaian ohikoa da etxe izenak oso luzeak izatea, luzeenak Euskal Herrian, lehenengo osagaia auzo izena izaten delako. Sarritan auzo izena izatez bertan egon zen lehenengo izena baino ez da. Etxe bakarra egon zen eta bigarren bat eraikitzean zerbait bereizgarri gehitu zioten berriari eta gehienetan zaharrari. Denboraren poderioz auzoa sortu zen eta etxe guztiek hasiera bera hartu zuten, auzoaren izena. Ahoz, gehienetan bigarren zatia besterik ez da erabiltzen. Kasu honetan* Lariz *auzoaren erdian zegoen etxea da.*

# Larizgoitia

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Laixgóti



43° 11' 13" 2° 33' 55" *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*"... la casería rústica titulada Larizgoitia... situada en la Cofradía o barriada de San Lorenzo jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende con su accesoria que está enfrente cinco mil y cuatrocientos pies cuadrados superficiales de planta solar, y la que se compone de sus correspondientes pisos, cuadras y habitaciones..."*
*DJE, 1/190. or. (1866)*

*Lariz* jauregiaren (**Ikus Lariz**) inguruko etxeetatik kanpo gelditzen den baserri honen gaineko lehen aipamenak XVII. mendean aurkitzen ditugu, hots, *Larizgoitia* (1685, BAHP, A1857/32. or.). Beste hainbat izenekin gertatzen den moduan, izen hau ia aldaketarik gabe heldu da gaur egun arte. *Lariz Goytia* (1704) eta *Lariz Goitia* (1745) aurkitzen ditugu Bizkaiko su-erroldetan, eta XIX. mende hasieratik, *Larizgoitia* (1810, BAHP, A23/11. or.) forma finkatuko da dokumentu guztietan: *Larizgóitia* (1859, BUA, Nmcr / 1967, BUA, CE). Berriztarren artean, *Laixgóti* da ahozko formarik erabiliena.

Bizitza biko etxea da, dotorea, kalekoen antzera eraikia. Egia esanda, elkarren ondoko etxe bi dira, teilatu bakarraren azpian eta, itxura areagotzeko, honen gailurra fatxada nagusiaren paralelo egin zuten. Bakoitzaren tipologia sinplea da eta oso modu garbian dauzka baoak antolatuta. Simetria da nagusi eta hiru ardatzetan zabaldu ziren atea eta leihoak. Hala, atea erdi-erdian dago eta alboetan, leiho bana. Gainean, lerrokatuta, hiru leiho, behekoen neurrikoak, eta ganbaran, beste hiru, baina txikiagoak. Erabilitako materiala harlangaitza da, harlanduarekin batera, ateetan eta leiho ertz guztietan. XIX. mende inguruan jasoko zuten.

toponimia

*Bizkaian ohikoa da etxe izenak oso luzeak izatea, luzeenak Euskal Herrian, lehenengo osagaia auzo izena izaten delako. Sarritan auzo izena izatez bertan egon zen lehenengo izena baino ez da. Etxe bakarra egon zen eta bigarren bat eraikitzean zerbait bereizgarri gehitu zioten berriari eta gehienetan zaharrari. Denboraren poderioz auzoa sortu zen eta etxe guztiek hasiera bera hartu zuten, auzoaren izena. Ahoz, gehienetan bigarren zatia besterik ez da erabiltzen. Kasu honetan goiko aldeko etxea da.* Goitia *hitza oso zaharra da eta gaur egun ez da erabiltzen,* goikoa *baizik, baina oso arrunta da deitura eta toponimoetan.*



# Larizkoerrota

etxebizitza

Aldaerak: Larizgoikoa / Goikoa
Ahozkoa: Góikue / Errótie



43° 11' 23" 2° 34' 14" Berriz Iruditan / J.A. Ramos

*Lariz* jauregiaren (**Ikus Lariz**) lurretan kokatzen den errota dugu honako hau, seguruenik jauregira lotuta egongo zena, eta ondorioz, ez da dokumentazioan agertzen. *Oka* errekatik urak aprobetxatuz egin du bere ibilbidea baserri-etxe honek. Orain erdi erorita egon arren, gutxienez XIX. mendetik dokumentatuta dago, beti ere *Lariz* etxe handiari lotuta. XX. mende hasieran, Udal-errolda batean *Molino de Lariz* (1910, BUA, RU) moduan jasotzen da. Berriztarren artean, *Góikue* edo *Errótie* ahoz formak erabiltzen dituzte.

Errota izan zen baserri hau, eta kontserbatzen du oraindik ere estoldaren arkua izandakoa. XVIII. mende amaieran egin zen, eta hurrengo mendean eraberritu zuten. Orduko etxe askoren ereduei jarraituz, sarrerako atea alde batean dauka, eta solairu horretako leiho gutxiak harlanduz egindakoak dira. Goikoak eta teilatupekoak, ostera, ugariagoak dira, eta egurrezko dintela daukate. Bi isurkiko teilatua dauka, eta eraikitzeko harlangaitza erabili zuten, kantaletan izan ezik, horiek harlandua baitaukate.

toponimia

*Bizkaian ohikoa da etxe izenak oso luzeak izatea, luzeenak Euskal Herrian, lehenengo osagaia auzo izena izaten delako. Sarritan auzo izena izatez bertan egon zen lehenengo izena baino ez da. Etxe bakarra egon zen eta bigarren bat eraikitzean zerbait bereizgarri gehitu zioten berriari eta gehienetan zaharrari. Denboraren poderioz auzoa sortu zen eta etxe guztiek hasiera bera hartu zuten, auzoaren izena. Ahoz, gehienetan bigarren zatia besterik ez da erabiltzen. Kasu honetan Lariz auzoko errota da. Errota izenaz zerbait gehiago jakiteko ikus* Bekoerrota (Okango) *sarreran esaten dena.*

# Larizondo

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa:



*43° 11' 19"* *2° 34' 13"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

XXI. mende hasieran egindako txalet berria dugu. *Lariz* (**Ikus Lariz**) baserriaren *Etxeondo* soroan eraikia zen, eta hortik hartu du izena: *Lariz* (*etxe*) *ondo*.

Erripa aprobetxatuz, azpian garajea kokatu zuten. Bi isurkiko teilatua duen etxea da eta bere fatxada nagusia teilatuaren ardatzaren arabera antolatuta dauka. Erdia zeharo gailentzen da, baoen eta horien pertsianen kolore ilunari esker. Bertan, beheko solairuan hiru dira leihoak, elkarren ondoan, eta goikoan, teilatupean, balkoia dauka, zeinera leiho luze bi zabaltzen diren. Aldamenetan, ostera, leiho bakarra du ezkerraldean, eta bestean, atzeratuta eta aterpe gisa, sarrera. Hormak luzituta ditu, eta ertzak harlanduz estalita.

toponimia

*Arestian aipatu den moduan (***Ikus Larizgoikoa***) jatorrian etxe bakarra egon zen eta bigarren bat eraikitzean zerbait bereizgarri gehitzen zioten berriari eta gehienetan zaharrari. Kasu honetan* Lariz *(***Ikus Lariz***) palazioaren ondoan eraikitako etxea dugu.*



# Lasuen etxebizitza

Aldaerak: Lasuenemetikoa / Lasuenbekoa
Ahozkoa: Lásuen

*"... la casería rústica titulada Lasuen emeticoa... situada en la Cofradía o barriada de San Lorenzo, jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende con inclusión de la tejabana horno y terreno antusano doscientos treinta y cuatro estados... la que es de dos viviendas, y se compone de piso bajo y alto, con sus correspondientes divisiones cuadras y habitaciones..." DJE, 3/ 9. or. (1870)*



*43° 11' 1"* *2° 33'23"* *Berriz Irudítan / T. Angoitia*

*Arietzu* aldean kokatzen den baserri honen gaineko lehen aipamenak Bizkaiko su-erroldetan aurkitzen ditugu XVIII. mende hasieran, hots, *Lasuen* (1704). *Lasuen* izen-osagaia duen beste baserritik bereizteko (**Ikus Lasuenandikoa**), era desberdinak hartuko ditu dokumentazioan: *Lasuen de Iuso* (1745, Bizkaiko su-erroldak), *Lasuen de aca* (1825, PE/1825), *Lasuen emeticoa* (1857, BUA, Viv), *Lasuen Hemetikoa* (1910, BUA, RU) eta *Lasuen emeticoa* (1967, BUA, CE). 1859ko izendegian aldiz, *Lasúen* (1859, BUA, Nmcr) moduan dokumentatzen dira baserri biak. Auzotarrek, *Lásuen* forma erabili izan dute, eta *Lasuenemetikoa* edo *Lasuenbekoa* legez ere ezagutu dute baserri hau.

Baserri etxe handia, bizitza bikoa. Isurialde biko teilatuaren azpian hiru pisu eta ganbaradun etxea dago, oso zabala, fatxada ia modu simetrikoan antolatuta daukana edo, hobeto esanda, ardatza indartuta. Hala, erdian atartea dauka, arku eder baten bidezko sarreraduna; lehenengo solairuan, leiho luzea; bigarrenean, leiho arrunta, eta ganbaran, leiho txiki bakarra. Alde banatan, eta solairu bakoitzean, leiho arruntak. Eraikitzeko erabilitako materiala harlangaitza da, harlanduzko baoekin, harlanduzkoa den moduan atartearen barrualdea. Ganbara aldean, berriz, horma luzitu eta margotuta dago. Bere ezaugarrien arabera, esan daiteke XIX. mende amaieran edo XX. mende hasieran egindako etxea dela. Eta egitea agindu zuena, ostera, inskripzio bati esker dakigu, Ipar Mendebaldeko fatxadako leihoburuan idatzi zutelako: *"ESTA CASA IZO / JUAN DE LASUEN"*.

toponimia

*Bi dira Euskal Herrian* -suen *amaiera duten izenak, Lasuen eta Besuen (***Ikus Betzuen***), biak Berrizen eta inor ez da sekula esangura azaltzera ausartu. Agian bigarren osagaia* -guen *izan liteke aurrean* -s- *edukitzeagatik* -uen *bihurtua. Hori horrela balitz pentsa genezake* lats *"erreka" hitza dugula eta esanahia "errekagoien" dela, baina oso zalantzazkoa da etimo hau.*





# Lasuenandikoa (-a) etxebizitza

Aldaerak: Lasuengoikoa
Ahozkoa: Lásuen / Lásuen goikúe



43° 11' 1" 2° 33' 19" *Berriz Iruditan / T. Angoitia*

*"... la casería rústica titulada Lasuen-andicoa... situada en la barriada de San Lorenzo jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende noventa y seis estados... y la que se compone de sus correspondientes pisos, cuadras divisiones y habitaciones..."*
*DJE, 3/ 54. or. (1871)*

Arestian aipatu dugun moduan, jatorrizko *Lasuen* etxeetatik (**Ikus Lasuen**) bigarrena dugu honako hau, *Lasuenandikoa*. Topatu ditugun aipurik gehienetan, *Lasuen Andicoa* (1757, BAHP, A854/30. or.) moduan agertzen da, inguruan duen Lasuen baserritik bereizteko. Lehen azaldu dugun moduan, bestea *Lasuen de Iuso* (1745, Bizkaiko su-erroldak) moduan dokumentatzen zen bitartean, hau *Lasuen de Suso* (1796, Bizkaiko su-erroldak) edo *Lasuen de alla* (1825, PE/1825) moduan agertzen da agirietan. XIX. mende erdialdetik aurrera *Lasuen-andicoa* (1871, DJE, 3/ 54. or.) forma nagusitzen da, gaur egun arte horrela mantenduz; *Lasuen-andicoa* (1928, BUA, 32. or.) eta *Lasuen andicoa* (1967, BUA, CE) formak izanik horren adibide. Ahozko erabilpenean, *Lásuen* edo *Lásuen goikúe* dira formarik erabilienak.

Baserri-etxe galanta da, lau isurkiko teilatuduna, gutxitan ikusten dena baserrietan. Ez du zaharberritze askorik izan, eta bistan ditu XVI. mendean usatzen ziren silarriak ipar-mendebaldeko fatxadan. Alabaina, baserria, oro har, beranduagokoa da, eta XIX. mende hasieran hartuko zuen gaur egun daukan itxura.

Fatxada nagusia atarteko arkuak markatzen du, eta horrek egiten ditu egituraren antolatzaile lanak. Izan ere, horren aldamenetan zabaltzen dira leihoak: bina alboetan eta beste horrenbeste lehenengo solairuan, horiei gaineko bi txikiak gehitu behar zaizkielarik. Harlangaitza erabili bazuten ere, baoak harlanduzkoak dira. Horretan salbuespen dira beste fatxadetakoak, leihoak eta ateburuak egurrezkoak direlako.

toponimia

*Bi dira Euskal Herrian –suen amaiera duten izenak, Lasuen eta Besuen (***Ikusi Betzuen***), biak Berrizen eta inor ez da sekula esangura azaltzera ausartu. Agian bigarren osagaia* -guen *izan liteke aurrean -s- edukitzeagatik* -uen *bihurtua. Hori horrela balitz pentsa genezake* lats *'erreka' dugula eta esanahia 'errekagoien' dela, baina oso zalantzazkoa da etimo hau. Kasu honetan izenaren bigarren osagaiak beste aldean dagoena esan gura du,* -Onaindiaren *kontrakoa.*



# Lasuengana

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Lásuen



43° 11'2" 2° 33'22" Berriz Iruditan / J.A. Ramos

*Lasuen* (**Ikus Lasuen**) eta *Lasuenandikoa* (**Ikus Lasuenandikoa**) baserrien inguruan eraikitako txaleta dugu hau. Haren kokapenari erreparatuta, *Lasuengana* izena jarri diote.

Txalet berria, euskal baserriaren aztarnak dituena bere ezaugarrietan. Isuri biko teilatudun etxea da eta pisu bitan antolatzen da. Simetrikoa ez bada ere, badu indartuta daukan gunea, sarrerako dinteldun atarteak, gaineko balkoi luzeak eta etxearen frontoiak markatuta. Aldamenetan, leihoak.

Harria erabili zuten oinarria estaltzeko eta atarteko eta etxearen kantalak egiteko. Bestalde, luzituta dago eta frontoi aldean, adreilua erabili zuten, egurrezko egitura imitatzearekin batera. Egurra, berriz, leiho eta ateburuak egiteko, baita pertsianentzako ere, materialen eta kolorearen jokoa indartuz.

toponimia

*Bi dira Euskal Herrian* -suen *amaiera duten izenak, Lasuen eta Besuen (***Ikus Betzuen***), biak Berrizen eta inor ez da sekula esangura azaltzera ausartu. Agian bigarren osagaia* -guen *izan liteke aurrean* -s- *edukitzeagatik* -uen *bihurtua. Hori horrela balitz pentsa genezake* lats *'erreka' dugula eta esanahia 'errekagoien' dela, baina oso zalantzazkoa da etimo hau. Izenaren bigarren osagaiak aldiz kokapenari erreferentzia egiten du,* Lasuen *baserriaren goiko partean kokaturiko txaleta dela alegia.*




# Legorreta etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Liórreta



*"... la casería rústica titulada Legorreta... situada en jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende con inclusión del terreno basurero que está en frente cincuenta y cuatro estados equivalentes dos areas y seis centiareas de cabida, y la que se compone de sus correspondientes pisos, divisiones y habitaciones..."*
*DJE, 2/ 118. or. (1867)*

*43° 10' 39"* *2° 34' 53"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Sallobente-Mendibil eta Eitua kofradien arteko mugan kokaturiko baserria da honako hau. Beste hainbat kasutan bezala, baserri honen izena aldaketa barik dokumentatu da XVIII. mende amaieratik hona. Horrela, 1796ko Bizkaiko su-erroldan *Legorreta* aurkitzen dugu, eta izen bera jasotzen da 1859ko izendegian zein XX. mende hasierako erroldan (1910, BUA, RU). 1930eko hamarkada amaieran, ahozko erabileraren ondorioz, *Liorreta* (1939, BUA, 37. or.) forma jasotzen da, eta hori da berriztarrek erabilitako ahozko forma ere *Liórreta*.

XX. mendean berrikuntza sakona eduki duen baserria da, gaur egun daukan itxura hartu arte, nahiz eta XVIII. mende bukaerakoa edo XIX. mende hasierakoa izan daitekeen. Bi isuritako teilatuaren azpian fatxada ordenatuko etxea antzeman daiteke, pisu bi eta ganbaraduna. Atarte zabala alde batean dauka. Bere egunean egurrezko dintelduna zen, baina orain hormigoizkoa ageri da, dobelak imitatuz. Ondoko leiho bakarra, ostera, harlanduzkoa da. Goiko hiru leihoek hegi molduratua daukate eta hauetan ere harlandua erabili zen, eta dobelak eta giltzarria irudikatu ziren. Ganbarakoak neurri ezberdinetakoak dira teilatuaren formari egokitu zaizkiolako. Harlangaitza erabili zuten etxea jasotzeko eta juntura guztiak zuriz markatuta daude.

toponimia

*Toponimo xehe eta arrunta etxe-izen bihurtu zena. Izenaren osagaiak lehor hitza eta ugaritasuna edo lekua adierazten duen -eta atzizkia dira. Gipuzkoan ere bada izen bera duen herria.*



# Lupita

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Lupítte / Lupítte

*"... la casería llamada Lupita... sita con ellos [sus pertenecidos] en la Anteiglesia de Berriz... ocupa sesenta y cinco estados cuadrados o sean doscientos cuarenta y siete metros con sus antusanos; se compone el piso llano de zaguan, cocina aposento, cuadra y horno, el principal de salita, dos cuartos, desban y pajar... "*
*DJE, 3/212. or. (1877)*



*43° 10' 53"* *2° 33' 8"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Baserri-taberna izandako eraikin honen gaineko lehen aipuak XVIII. mende erdialdean aurkitzen ditugu, hots, *Lupita Echevarria* (1738, BAHP, A123/31). Hortik aurrera, present izango dugu herriko dokumentazioan; baina izenaren bigarren osagaia, *echevarria* alegia, galtzen du: *Lupita* (1796, Bizkaiko su-erroldak), *Lupíta* (1859, BUA, Nmcr) eta XX. mendeko *Lupita* (1967, BUA, CE). Berriztarren artean, *Lupítte* edo *Lupítte* ahozko formak izan dira erabilienak.

Desagertzeko zorian egondako baserri etxea da eta ia berriro jaso dutena azkeneko berreraikitzean. XVIII. mende amaierako edo XIX. mende hasierako trazan eraikitakoa da eta noizbait eskuma aldean beste eraikin bat erantsi zioten, harlanduzko leiho bakarra gordetzen duena. Etxe printzipalak aldamenean atartea dauka, zurezko dintelak babestua, eta ondoan, leihoa. Lehenengo pisuan, hiru leiho, erdikoa balkoi bihurtuta. Eta ganbaran, alde batean, beste leihotxo bat. Harlangaitzaz eraikitako etxea da, eta baoak hormigoizko plaka batez markatu dituzte. Teilatua bi isurkitakoa da.

toponimia

*Beste kasu askotan bezala (Besoita edo Otsaita) pentsatu behar dugu izen honetan dugu la pertsona izen bat, Loperen eratorri bat, seguru asko,* Lupiola *(***Ikus Lupiola***) izenean bezala eta esanahia iluneko* -ita *atzizkia. Agian* Loperena *edo* Lopene *esango genuke gaur egun*

# Mendibarrena

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa:



*43° 10' 48" 2° 34' 40"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

XX. mendeko eraikina dugu honako hau, azken zentsoetan *Mendibarrena* moduan azaltzen dena.

XX. mendearen erdialdeko etxea, pisu bakarrekoa eta ganbaraduna. Ohikoa izaten zen sarrera alboan izatea, harrizko zokalo baten gainean eraikitzea, askotan sotoa kokatzeko, eta gainean, etxebizitza. Etxea ez da simetrikoa, baina fatxada guztiz ordenatuta dauka teilatuaren gailurraren arabera. Horrela, ikusten dira lerrokatua bi leiho pisuko, eta alderik zabalenean, beste bat, handiagoa eta dintel kurbatuduna. Fatxada luzituak ditu eta kantalak eta bao ertzak marko zuriaz indartuta dauzka.

toponimia

*Izen berria dugu, baina Bizkaiko tradizioari jarratzen diona. Hiri eta herri askotan, beheragoen dagoen kaleari* Barrenkale *deitzen zaio, eta, era berean, hemen ere, mendiaren barrenean edo beheko aldean dagoen baserria hau izendatzeko* Mendibarrena *hautatu dute.*



# Mertzedariak

komentua

Aldaerak:
Ahozkoa:



*43° 10' 55"* *2° 34' 25"* *Berriz Iruditan*

XVI. mendean Gurutze Santuaren izenpean serora-etxe gisa hasi zena, XIX. mendean handituz joan zen, eta, hurrengo gizaldian egindako obrei esker, gaur egun daukan itxura hartu zuen. Trentoko Kontzilioaren arauei jarraituz, mojek klausuran bizi behar zuten, eta, dirudienez, Berrizen ez zeukaten horretarako lain. Aitzitik, haiei ere heldu zitzaien unea, eta orain ikus daitekeen eremu handia eratzeko abagunea izan zuten. Komentuaz gain, hari atxikitako kapera eta eskola dira elementurik aipagarrienak.



*Mertzedariak / Berrizko Vera Cruz komentuaren krokisa ( 1900. urte inguruan)*

toponimia

*Mesedetako ordena edo Mesedetako Gure Ama eta Gatibuen Erosketetarako Errege Ordena Militarra (Ordo Beatæ Mariæ Virginis de Redemptione Captivorum) 1218an sortu zen Bartzelonan Santa Eulalia izenaren azpian. Helburua musulmanen esku esklabu zeuden kristauak askatzea zen. 1317an erlijio ordena bihurtu zen. XIX. mendean esklabuak askatzeko beharra amaitzean ordenak bere helburuak aldatu zituen eta beste alor desberdinen artean irakaskuntzan aritu ziren, nahiz eta Berrizkoak klausurakoak izan. Orden honi zor zaio Mesedeetako Andra Mariarekiko jaia.*





# Mesedetako Ama *ermita*

Aldaerak:
Ahozkoa: Mójen ermítea



*43°10'44"* *2°34'18"* *Berriz Iruditan*

Ermita berria da, nabe bakarrekoa eta abside kurbatuduna, labe gangaz estalia, Erromaniko garaiko beste eliza askoren antzera. Desberdina da oso, konparatzen badugu Berrizko beste ermita batzuekin. Izan ere, egurra erabili zuten teilatua armatzeko baina, euskarri moduan, diafragma arkuekin baliatu, elementu zeharo berria inguruko ermiten tradizioan. Arkuak denak dira puntu erdikoak, barrukoak, leihoetakoak, sarrerakoa eta elizpera sartzeko biak ere halakoak dira. Azken hauek teilatuaren okerduraren araberako neurrikoak dira. Harrizko zokalo baten gainean jaso zuten eta hormak luzitu eta zurituta daude, baita kanpai-horma ere. Bere estiloagatik XX. mendearen erdialdean kokatuko genuke.

toponimia

*Andra Mariarekiko jaiera edo debozioa oso handia izan da kristautasunaren hasieratik eta Europako eskualde askotan Ama Lurra, gurean Mari, ordezkatu zuen. Fededunek beregana jotzen dute mesede eske, ama izanik Jainkoaren aurrean lagunduko duelakoan.*



# Okagoikoa

etxebizitza

Aldaerak: Zubigane Oka
Ahozkoa: Óka / Óka goikúe



43° 11' 37" 2° 34' 13" Berriz Iruditan / J.A. Ramos

Berriz eta Mallabia arteko mugan kokatzen den baserri-errota honen gaineko aipamenik ez dugu aurkitu dokumentazioan. Hala ere, *Oca* (1967, BUA, CE) moduan erregistratuta aurki-tzen dugu XX. mende amaierako eraikin-erroldan. *Oka errekaren* uren ondoan kokaturik daudenez, etxe hau zein honen ondoan dagoen *Okabekoa* (**Ikus Okabekoa**) dira errekari izena ematen diotenak. Berriztarren artean, etxe biak *Óka* moduan ezagutu izan dira, nahiz eta bien artean bereizi, honako hau *Óka goikúe* izanik. Egungo jabeek *Zubigane Oka* izenaz ezagutzen dela ere adierazi dute, halako aipamenik inon aurkitu ez dugun arren.

Errota izandakoan eraikitako baserri etxea da. XIX. mendean egiten ziren trazan jasoa. Izan ere, isurialde biko teilatuaren babesean etxe luzenka ikusten da, pisu bi eta ganbaraduna. Fatxada nagusiak oso izaera ordenatua du, erdiko ardatzaren arabera antolatua. Atea, erdian, eta leiho bana, aldamenetan. Goian, leiho arruntak, alboetan, eta leiho luzea, erdian. Eta gorengo, berria, balkoi sakona. Egin dioten eraberritzean harria bistaratu diote, baina jatorriz eraikitzeko erabili zuten harlangaitza luzitu eta pintatuta izango zuen, baita leihoetan ere, hauetan zurezko dintela ikusten da eta. Harlandua soil-soilik kantaletan antzematen da.

toponimia

Oka *toponimoa oso arrunta da Euskal Herrian eta inguruan. Horrela deitzen dira Gernika eta Mungia zeharkatzen duten ibaiak eta Arabako udalerri bat. Ez dira bakarrak eta Burgos iparraldean, euskararen mugetan Villafranca de Montes de Oca dugu. Badirudi* oka *hitzak 'arroila' esan nahi zuela eta egia da esangura hori betetzen dela leku askotan. Hala ere Irigoienen ustez kasu batzuetan "baratza" adiera bazuen eta* okaran *izango zen* basaran*-en kontrakoa. Kasu honetan izenaren bigarren osagaiak* goiko aldekoa *dela esaten digu.*

# Okabekoa (-a) etxebizitza

Aldaerak: Oka / Oka Landaetxea
Ahozkoa: Óka / Óka bekúe



*43° 11' 36"* *2° 34' 13"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Arestian aipatu bezala, ia aipamenik ez dugu aurkitu baserri-errota honi buruz, XX. mendeko azken erroldan izan ezik, hots, *Ocabecoa* (1967, BUA, CE). Dena den, egun landetxe den errota zaharberritu honen gaineko informazioa jasotzen da haren web orrian (www.okalandaetxea.com).

Bertako datuen arabera, 1550etik 1910era arte, eraikinak errota gisa funtzionatu zuen. XIX. mende erdialdera, uhaldi batek eraikina behera bota zuen, eta ia bere osotasunean berreraikia zuten. XX. mende hasieran, industrializazioaren eraginez, errota zaharra erabiltzeari utzi zitzaion, eta argindarra sortzeko makina ezarri zuten bertan, Alemaniatik ekarritakoa. Uraren indarrekin, elektrizitatea produzitzeari ekin zitzaion, ondoren Berrizko udalari eta ondokoei eta inguruko baserritarrei saltzeko.

*Okagoikoa* (**Ikus Okagoikoa**) baserriarekin gertatzen den bezala, berriztarrek *Óka* moduan ezagutzen dute hau ere, eta *Óka* bekúe ahozko forma erabiltzen dute beste eraikinetik bereizteko.

toponimia

*Arestian aipatu dugun moduan (***Ikus Okagoikoa***)* Oka *toponimoa oso arrunta da Euskal Herrian eta inguruan eta "arroila" esan nahi omen zuen.* Okagoikoarekin *alderatuta, kasu honetan izenaren bigarren osagaiak* beheko aldekoa *dela esaten digu.*





*Berriz Iruditan / T. Angoitia*

Errota eta zentral hidroelektriko izandakoaren lekuan altxatutako eraikin multzoa da, gaur egun landetxe bihurtu dena. Hiru bolumenek osatzen dute. Funtzioari eta parajeari egokitzen zaizkio guztiz, erreka ondoan eta aldats handian, erripan, azken finean, erabat integratuta dagoelarik.

1850eko uhaldiak eraikina erabat hondatu zuen, eta gaur ikusten duguna gero berreraikitakoa da. Hala ere, bere horretan mantentzen dira oraindik ere, antapara, estolda eta ondorengo zentralaren makineria ere, besteak beste.

Eraikinik handiena eta trinkoena gorago dagoena da. Harlangaitzez burutu zuten, zurezko dintelez hornitutako baoak ditu eta lau isurkiko teilatua. Erdikoak, berriz, orduko etxeen egitura du. Bi isurkiko teilatua dauka, eta harlanduz eginda ditu kantalak eta baoen ertzak. Solairu nagusian hiru leiho dauzka, erdikoa luzea izanik, eta ganbaran, beste horrenbeste ditu, teilatuaren formari egokituta. Azkenik, hirugarrena eraikinik txikiena da, eta harrera-leku funtzioa egiten du.



# Olakua

desagertuta

Aldaerak:
Ahozkoa: Óla



Berriz Irudiatan

*"... la casa rústica titulada Olacua o Ferreira vieja, sin numeración, situada en la Cofradía o barriada de San Lorenzo jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende cuarenta y cinco estados, equivalentes a ciento setenta y un metros cuadrados superficiales de cabida... y la que se compone de pisos bajo, alto y desban, y es de una vivienda con sus correspondientes cuadras, divisiones y habitaciones..."*
*DJE, 1/241. or. (1866)*

*Oka erreka* ur-emariaren ondoan kokatutako ola dugu. XX. mendearen azken laurdenean desagertu zen, Berrizko institutua egiterakoan. Dena den, XIX. mendean aurkitzen dugu haren berri: *Olacua* (1866, DJE, 1/ 241. or.). XX. mendeko azken eraikin-erroldan, *Ola* (1967, BUA, CE) moduan ere erregistratzen da. Berriztarrek *Óla* ahozko forma erabiltzen dute desagertutako ola horri buruz hitz egiterakoan.

toponimia

*Irudi du izen argia dela* ola*, kasu honetan "burdina lantzeko lantegia" eta nongo kasua,* -ko *inguruan* -ku *egiten dena eta artikulua. Baina ezin dugu ahaztu* Olakueta *ezaguna* Olakurueta *dela XVIII. mendean eta zail dela* ko>ku *aldaketa hain aspaldian aurkitzea.*



# Pozaena etxebizitza

Aldaerak: Pozaetxea
Ahozkoa:



43° 10' 56" 2° 34' 33" Berriz Iruditan / J.A. Ramos

Abaitua aldean egindako bizitza bakarreko txaleta dugu. Orain arte eta jabeen abizenari jarraiki, *Pozaetxe* izenez ezagutu bada ere, toponimia-ikerketaren harira proposatu zitzaien *Pozaetxe* baino *Pozaena* zela forma zuzena.

1987ean egindako bizitza bakarreko txaleta da. Etxe soila da, eta bi bolumenek osatzen dute. Bata bestea baino zerbait altuagoa da, eta aldamen batean dagoen aterpeak batzen ditu. Bi solairu dauzka, eta bao denak leihoak dira. Hormak luzituta eta margotuta daude, eta horietan gora doan huntzak alaitzen du etxearen monokromia.

toponimia

*Etxe izen honetan Urduñakoa den* Poza *deitura eta etxe esanahia duen* -ena *atzizkia ditugu.*

# San Kristobal Ixiki ermita



43°11'51" 2°34'45" *Berriz Irudikan / A. Arbulu*

Kondairak dioenez Kristobal, kristautu eta gero, bere bekatuak zuritzeko bidaiariak garraiatzen zituen ibai baten ertz batetik bestera. Egun batean umetxo bat agertu zen eta sorbalden gainean igotzean bere pisuaz galdetu zion, ikaragarria baitzen. Orduan umeak jakinarazi zion Jesus Haurra zela eta bere gainean zeramatzala munduko bekatu guztiak. Segituan Jesusek berak bataiatu zuen Kristobal. Izenak "Kristo darama" esan nahi du gertaera horrengatik. Bere jaia uztailaren 24an zen, baina geroago uztailaren 10era mugitu zen Eliza Katolikoak ez baitu jadanik santutzat hartzen. Ortodoxoek, berriz, santutzat dute.

Bidaiarien zaindari den santuaren izenpean egindako ermita da Berrizkoa, atal bakarrekoa. Alde batean bakarrik dauka elizpea, eta, ohituraren kontra, albo horretako horma desagertu egin da, haren lekuan egurrezko hesia egin dutelako, barrualdea ikusi ahal izateko. Atea ere hesian kokatu dute. Oso kalitate oneko harriaz egin zuten, eta aterpeari eusteko egurrezko zutikoak ditu, harlangaitzezko zokaloaren gainean.



# Txirriena

etxebizitza

Aldaerak: Kotxeragoikoa
Ahozkoa: Txírridxena

*"... la casería rústica titulada Cochera de arriba, sin numeración, situada en la Cofradía o barriada de San Lorenzo jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende trece estados, equivalentes a cuarenta y nueve centiareas..."*
*DJE 1/244 or. (1866)*



43°10'38" 2°34'49" Berriz Irudita / J.A. Ramos

Bizitza bateko baserri honen gaineko aipamenik ez dugu aurkitu; baina jabego-erregistroan aurkitutako informazioaren harira, badirudi *Cochera de arriba* hau jauregiarekin erlazionatuta dagoela, eta *Berriz* (**Ikus Berriz**) jauregiaren parkearen beheko partean zegoen *Cochera* (**Ikus Cochera**) delakoarekin batera jauregiaren bi eraikin gehigarriak zirela. Berriztarren artean, aldiz, ahoz-kotasunean beti *Txírridxena* moduan ezagutu izan da.

Elkarren hurrengo dauden hiru gorputzez osaturiko etxea da, estu-estua duen alturarako, nahiz eta bakarrik behekoa eta lehengo solairuak baino eduki ez. Harlangaitzaz altxatutakoa bada ere, kantalak, ateak eta leihoak harlandu ederraz inguratu ziren. Beranduago leiho berriak zabaldu dituzte, zurezkoak, eta ateren bati aterpea egin diote. Batasun itxuraren ostean, oraindik igarri daiteke zein den lehenengo egindakoa, erdikoaren ateburuak etena egiten baitu bidea kontran dagoen etxearen kantalekin. XIX. mendeko etxea dela esango genuke.

toponimia

*Herrian dagoen herri etimologiak gurdiek eta ibailgailuek egiten zuten zaratarekin "txirriarekin" lotzen badu ere, pentsa genezake bertako inori deitu zutela* Txirri *horrexegatik, zaratarengatik, -ena atzizkia pertsoan izenei gehitzen baitzaie.*

# Udaletxezarra etxebizitza

Aldaerak: Kartzela / Eskolak
Ahozkoa: Kontzéju



*Udaletxea, Guregipuzkoa.net / Casa consistorial © CC BY-SS: Ojanguren, Indalecio.*

*"... una casa denominada consistorio, en jurisdicción de la anteiglesia de Berriz, y término o barrio de la parroquia: esta casa que consta de piso llano con tres altos y mide con inclusión de los vuelos salientes y goteras una superficie total de doscientos un metros cuadrados y cincuenta centímetros... Ayuntamiento de la anteiglesia de Berriz... es dueño y viene poseyendo a nombre propio y a título de tal, la casa de este numero desde tiempo inmemorial, con destino a Consistorio u oficinas o dependencias municipales, sin que se tenga conocimiento de la persona o Corporación de quién se hubiere adquirido..."*
*DJE 8/36 or. (1908)*

Argi eta garbi izen hau eraikinak izan zuen erabilpenarekin loturik dago. Herritarren artean horrela ezagutzen da. Baina eraikin honek bere historian zehar *Concejo* (1857, BUA, Viv) moduan ere dokumentatu da. Dena den udal administrazioa jasotzeaz aparte, beste erabilpen batzuk izan ditu, tartean eskola eta kartzela izan zen.

Egin zen estiloari begiratzen badiogu, duda barik esango genuke gertu zegoen *Olakueta* jauregiarekin (**Ikus Olakueta**) estu-estu lotuta zegoela, nahiz eta hura baino txikiagoa izan. Palazioen antz handiagoa zuen Euskal Herrian hain indartsuak izan ziren udaletxe barrokoena baino, arkupebakoa baitzen. Etxe trinkoa zen, hiru pisu-

toponimia

Kontzeju *hitza erabiltzen da Bizkaian udala izendatzeko. Hitza erromantzezkoa da eta oso arrunta da Araban eta Bizkaiko mendebaldean, Enkartazioetan. Azken honetan, esaterako, ez da Ayuntamiento esaten, concejo baizik. Araban eta Urduñan, berriz, kontzejua ez da udala, udalaren barruan dauden entitatea administratiboak baizik. Gure kasu honetan 'udaletxe' esangurarekin erabiltzen zen hitza bertan egon baitzen.*





*Dantzariak Santa Isabel jaietan, atzean Udaletxezarra / Berriz Irudita*n

takoa. Goranzko tendentzia sumatzen zen bere egituran eta neurri oneko baoak hiru ardatzen arabera antolatu zituzten, simetria ardatzari jarraituz, beheko plantan ezik. Hala, erdian sarrerako atea zeukan eta aldamen batean, leiho luze bakarra. Solairu nagusia, ohiturari jarraituz, lehenengoa zen eta bertan zegoen balkoia, erdian, batzar gela iragarriz. Alboetan, beste leiho luze bana eta goian, hiru leiho txikiagoak, behekoekin lerrokatuta. *Olakuetako* jauregian legez, hormak luzituta zituen eta harlandu ederra bao guztien ertzetan eta kantaletan, erritmo bati jarraituz. Kalitatearen seinale, etxearen erremate gisa, tamaina handiko moldura zeukan. Bazuen balkoiaren goialdean plaka bat, segurutik inskripzioa izango zuena idatzita, baina, tamalez, ez zaigu haren berririk ailegatu. *Besoitaetxebarriak* eta *Arangurenetxebarriak* (1851) kontserbatzen dituzte antzeko plakak eta, hori irizpide hartuta, XIX. mendearen erdialdekoa izan zitekeela pentsatzen dugu.

# Ugaldea (-a) etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Uhélde



43° 11' 11"   2° 34' 14"   *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*"... la casería rústica titulada Ugaldea... de la cofradía de San Lorenzo de la anteiglesia de Berriz,... se compone de piso llano con zaguan cocina y cuadra y de un aditamento horno por el lado Este, de piso principal con un cuarto sala y pajar, y encima camarote, y mide su planta solar doscientos diez y nueve metros cuadrados..."*
*DJE, 6/ 108. or. (1892)*

*Oka erreka* (**Ikus Oka erreka**) inguruan kokatzen den baserri honen gaineko lehen aipamenak ere XVIII. mendean aurkitzen ditugu, hots, *Ugaldea* (1702) BAHP, A1961/32. or.). Bizkaiko su-erroldetan ere nabariak dira *Ugaldea* (1704 eta 1796). Inguruan dagoen *Ugalderrota* (**Ikus Ugalderrota**) baserriarekin batera agertuko da dokumentu gehienetan, eta *Ugaldea* moduan jasotzen dira biak batera. Adibidez, 1859ko izendegian *Ugaldéas* (1859, BUA, Nmcr) agertzen dira. Bestela, ez da aldaketarik nabari izen honetan, dokumentu guztietan *Ugaldea* forma izanik erabiliena. Auzotarren artean, *Uhélde* da ahozko formarik erabiliena.

Bizitza biko baserria da, eta fatxadan ere igartzen da hori. Ezkerreko aldea XX. mendeko berrikuntza batean erabat aldatu bazuten ere, eskumako aldeari erreparatuta ondo baino hobeto ikus daiteke nolakoa izango zen jatorrian. XVII. mendean hedatuta egon zen tankerakoa zen, hau da, hiru gorputzez osatua. Aldamenetakoak harrizkoak dira, eta erdikoa da bitxiena. Atarte zabala zuen, egurrezko dintelak babestua. Eusteko, egurrezko zutikoa zuen erdian, eta bi alboetako kantalen ondoan, aldiz, zutoin bana. Lehenengo solairuan eta ganbaran, egurrezko egitura eta adreiluzko hormak ditu, tartean leihoren batekin. Teilatua bi isurkikoa da.

toponimia

*Antzina euskaraz, gaztelaniaz bezala,* ur *hitza erabili izan zen "ibai" edo "erreka" esangurarekin eta handik sortu zen* ugalde *"ur alde". Gure kasu honetan artikuluaz lagunduta ageri da. Nahiko arrunta da* Ur>Ug *aldaketa eta Berrizen bertan dugu, esaterako* Ugarte *("Ur arte" edo "erreken artean").*



# Ugalderrota

etxebizitza

Aldaerak: Txakilloena
Ahozkoa: Txákillona

*"... la casa molino titulada Ugaldea... en el barrio de San Lorenzo de la anteiglesia de Berriz... se compone de piso llano con cocina, un cuarto y cuadra, y las moliendas con una piedra para maiz con sus correspondientes utiles, y en la parte superior camarote, y mide su planta una superficie de ciento nueve metros cuadrados..."*
*DJE, 6/ 111. or. (1892)*



*43° 11' 5"* *2° 34' 17"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Berriztarren artean *Txakilloena* izenez ezagutzen da baserri-errota hau, ahozko forma *Txákillona* izanik. Arestian aipatu dugun *Ugaldea* (**Ikus Ugaldea**) baserriarekin estu lotuta agertzen da dokumentazioan. Berez, dokumentu guztietan forma berarekin aipatzen dira. Bizkaiko suerroldetan, esaterako, *Ugaldea* (1796) agertzen zaigu. 1825eko polizia-erroldan, *Ugaldea mayor* (1825, PE/1825) jasotzen da lehenengoz. Hortik aurrera, forma bera mantentzen da, nahiz eta jabego-erregistroko deskribapenari so eginez, ikusten dugu bertan "... *la casa molino titulada Ugaldea*..." jasotzen dela, izen bereko beste eraikinarekin bereizita.

Gauzak horrela, XX. mendearen bigarren erdialdetik aurrera ere, horrela identifikatzen da baserri hau dokumentazioan: *Ugalderrota* (1967, BUA, CE). Ikerketa toponimikoaren harira, komenigarritzat hartu dugu izenaren bigarren osagai hori mantentzea, *Ugaldea* baserritik bereizi ahal izateko.

Izenak adierazi moduan, errota izandako eraikina da. Horietan gertatzen den legez, funtzionaltasuna da nagusi, eta baoak modu irregular samarrean kokatuta ditu. Gainera, berriztatzelanetan dihardute, eta itxura zeharo aldatuko da. Edozelan ere, solairu biko etxea da, eta neurri oneko leihoak dauzka, zahar ez direnaren seinale. Harrizkoak dira hormak, eta harlandua soilik etxearen kantaletan erabili zuten. Isurki biko teilatuaz estalita dago.

toponimia

*Hitz arrunteko* uhalde-ren *mendebaldeko aldaera dugu* ugalde*. Hitzaren osagaiak argiak dira, ur eta alde, eta hiru esangura desberdin ditu. Batetik "ibaiaren ertza" da "orilla" eta bestetik, gainezka egiten duen erreka, eta azkenik ibaia, besterik ez. Beraz, "errekako errota" edo "ibaiaren aldeko errota" da esanahia.*

# Sarria

*Arria*
*Arriola*
*Asentzio Urdaiaga*
*Bidekurutzeta*
*Bolunbarri*
*Bolunbarriburu*
*Bolungarai*
*Bolunzar*
*Bolunzarburu*
*Errekaondo*
*Errekatxu*
*Errotatxu*
*Errotabarria*
*Errotetabarria*
*Eskolak*
*Iturbe*
*Iturbeazpikoa*
*Iturbeburu*
*Iturbegana*
*Iturbegoitia*
*Lazpita*
*Lazpitabekoa*
*Lazpitagoikoa*
*Lazpitalarra*
*Mugaburu*
*Oizko etxeak*
*Patala*
*Sarriamatza*
*Sarribeitia*
*Sarrigoitia*
*Sarriogonbe*
*Sarrionaindia*
*Sarriortuzar*
*Sarriugarte*
*Sarriurizar*
*Ubilla*
*Ubillabarria*
*Ubillaganekoa*
*Ugartebidea*
*Ugartebidetxebarria*
*Ugarteburu*
*Ugarterrota*
*Zereintza*
*Zumardia*





# Arria (-a)

etxebizitza

Aldaerak: Arrijauregi / Kalbona
Ahozkoa: Árri / Kálbona



*43° 11' 53"* *2° 36' 28"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Sarria auzoak eta Garaik bat egiten duten eremuan, *Arrierreka* ondoan kokatuta dago jauregi izandako baserri hau. Aurkitu dugun lehen aipu dokumentala 1704. urteko Bizkaiko su-erroldakoa da: *Arria*. Baina argi dago etxea askoz ere zaharragoa dela. Hortik aurrera, hainbat dokumentutan ageri zaigu, denetan era berdina mantenduz: *Arria* (1825), *Arria* (1866) eta XX. mendeko azken agerietan ere *Arria* (1967). Behin baino gehiagotan *Palacio de Arria* moduan agertzen bada ere, herrikoek *Arrijauregi* erabiltzen dute, izen jatorraren erdipurdiko itzulpena dena. Gaur egun, ahoz ohikoa da artikulurik gabeko *Arri* aldaera edo *Kálbona* ezizena erabiltzea.

Etxeak berriztatze-lan handiak jasan ditu, harrien tratamenduek agerian uzten duten moduan, eta handitu ere egin dute, bizitza bikoa bihurtu arte. Hala ere, bista-bistan du oraindik sasoi bateko dorre edo jauregi izanaren itxura, Errenazimenduko kalitatezko landa-etxeen tankerakoa. Oso dotorea da gorde duen fatxada nagusia, harlandu bikainaz eraikia. Era berean, ederra da ere albo batean kokatuta sarrerako arkua, dobela handi batekin, eta baita haren giltzarrian nabarmentzen den armarria ere. Beheko solairuan saieterak dauzka eta gaineko solairuetan, berriz, leiho txikiak. Pisuen artean ordena handi barik kokatuta daude, XVI. mendeko etxe askotan ikus daitekeen moduan, alboko fatxadan ez bezala. Baliteke jatorrian lau isurkitako teilatua izatea, nahiz eta egun bikoa duen.

## toponimia

*Izenaren esanahia argia da* harri *hitz arrunta eta artikulua, baina zertara dator izen bitxi hau etxe bat izendatzeko. Teoria bi ditugu izenaren nondik norakoak ezagutzeko. Aukera bat da* Arria *izeneko leku batean etxea eraiki izatea eta bertako izena hartu. Beste aukera dateke* Ormaetxea *kasuan bezala harrizko etxea izateagatik horrela deitzea, antzina etxeak zurezkoak baitziren. Gaur egun ez dago jakiterik, baina gure ustez kasu honetan lehenengoa izan daiteke azalpen logikoena.*



# Arriola

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Olá

*"... la casería rústica Ferrería de Arria... radicante en jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que ocupa un área de cincuenta y seis estados..."*
*DJE, 1/19 or. (1863)*



*43° 11' 48"* *2° 36' 27"* *Berriz Irudita n / J.A. Ramos*

*Arrierreka* ondoan kokatzen den baserria dugu honako hau, bere garaian ola eta errota izandakoa. Erreferentzia dokumental gutxi jaso ditugu eraikin honen gainean, seguruenik XVIII. eta XIX. mendeetako dokumentazioan *Arria* (**Ikus Arria**) jauregiarekin batera dokumentatu baitzen. 1863ko eskritura batean *Ferreria de Arria* (1863, DJE, 1/ 19. or.) eta *Molino de Arria* (1863, DJE, 1/ 15. or.) moduan agertzen da. 1967ko eraikin-erroldan agertzen da lehen aldiz euskarazko izena, *Arri-Ola* (1967, BUA, CE). Auzotarren artean, beste hainbat kasuetan gertatzen den moduan, *Olá* bezala ezagutzen da.

XIX. mendean oraindik ola eta errota zen eraikinaren gainean jasotako etxea da, eta sasoi horretako ezaugarriak ditu. Izan ere, goranzko joera nabaria da bere fatxada nagusian, arindu egiten dena goiko balkoi zabalei esker. Isuri biko teilatua dauka eta honen gailurrak finkatzen du etxearen ardatza. Horrela, sarrerako ate ederra erdian irekitzen da eta bere bi aldeetan, leiho bana. Lehenengo solairuan, alboetako leihoak errepikatzen dira eta protagonismoa egurrezko kareldun balkoi batek hartzen du. Ganbara aldeko erdialdeari ere beste balkoi batek ematen dio indarra. Harlangaitza erabili zuten hormak egiteko eta harlandua, ostera, etxearen kantal eta leihoetarako. Jatorrian, harlandua ezik, dena luzitu eta pintatuta egongo zen, baina azkeneko berriztatze lanetan azpiko harria bistaratu egin dute.

toponimia

Arria *edo* Arrijauregia *izeneko etxearen ola, gaur egun "Arria auzoko ola" esango genukeena.* Ola *hitzak bi esangura desberdin izan ditu euskaraz. Zaharrena, leku batzuetan bizirik dena, "kortabaso" dugu. Kortabasoak mendietan hesitzen ziren lur eremu biribilak ziren. Geroago hemen duen adiera hartu zuen, "burdina egin edo lantzeko lantegia". Sarritan ola hauek errota moduan ere erabiltzen ziren eta hau izan zen honen kasua ola izatetik errota izatera aldatu baitzen.* Arrijauregia *izenaz hitz pare bat esan behar dugu. Euskaraz horrelako izenak arruntak dira, batez ere izen berbera duten etxeak bereizteko, eta gure ondarea ere badirelako ahalegin berezia egin beharko genuke zaintzeko.*





# Asentzio Urdaiaga ermita

Aldaerak: Asentzio Txiki
Ahozkoa: Aséntzidxo / Úrdaidxa



*43°12'15"* *2°35'56"* *Berriz Iruditan / A. Arbulu*

Asentzio edo Igokundea Eliza kristauaren jaia da. Egun horretan Jesusen zeruratzea ospatzen da. Ebanjelioek diotenez, Kristo gurutzean hil eta hiru egunetara berpiztu egin zen. Berrogei egun pasatuta, apostoluen aurrean, Ezpiritu Santua bidaliko ziela agindu ondoren, Aitarenganako bidea egin zuen, zerura.

Urdaiagako parajean dago Jesukristoren Igokundeari eskainitako ermita, goialdean, askotan gertatzen den moduan. Oso eraikin dotorea da eta harlangaitza erabili arren batez ere hormak egiteko, kalitate onekoa da, kantaletako, leiho eta ateetako harlanduak lez. Elizpea oinaldean dauka, koloma klasiko bik eutsitako teilatupean. Horretatik ikus daiteke barrualdea, hormaren ordez, zurezko hesia duelako.



# Bidekurutzeta

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa:



*43° 11' 5"* *2° 36' 12"* *Berriz Irudita n / J.A. Ramos*

Garai bidean, Sarriarako bidegurutze ondoan 1997. urtean egindako bizitza bateko txalet berria dugu. Ingurune hau "*bidekurutzeta*" moduan ezagutzen denez, eraikin berriak izen hori hartu du. Landa-inguruan integratutako eraikina dela esan dezakegu, eta, horretarako, hormigoizko egitura alde batera utzi eta egurrezko egitura aukeratu dute. Materialak, harriak bereziki, desagertutako beste baserrietatik berrerabili zituzten.

Teilatuko gailurrak fatxadaren simetria-ardatza zehazteko balio badu ere, benetan ez da simetrikoa beheko solairuko ezkerraldea luzatu egin dutelako. Dena dela, ardatz hori oinarritzat hartzen badugu, etxearen tankera XVII. mendean zabaldu zen estilokoa da. Erdian, egurrezko dintelaren babeseko atartea, eta aldeetan, leiho bana. Goiko pisuan alderik aldeko balkoia dago, eta erdiko gorputzean, egurrezko egitura eta tarteko adreiluzko hormak. Materialen erabileraren jokoa polita da. Izan ere, behealde guztia harrizkoa da, harlanduzko kantalekin; hormak luzituta eta zurituta eta egurra ere aise erabili dute, leihoburuetan, ateburuetan, teilatuko armaduran eta hegalari eusteko besoetan. Landa-inguruan oso ondo integratutako eraikina da.

toponimia

*Etxe berria bada ere izen zaharra du, eraiki zutenean, Bizkaiko usadioari jarraiki, bertako izena eman baitzioten etxeari. Jokabide hau zuhur eta txalogarria da, benetan. Nahiz eta euskara batuan* gurutze *aldaera hobetsi mendebaldean* kurutze *eta horren laburdura den kurtze erabili izan dira. Hitza, agerikoa den bezala, latinetik dator, eta bi adiera desberdin ditu, bata objektua,* gurutzea, *eta bestea "bideen elkartze gunea", nahiz eta azken esanguraràko* kurtzio *ere erabili den. Amaieran ageri den atzizkiak kasu honetan ez du pluraltasun esanahirik, bakar bakarrik adierazten du leku bat dela.*

# Bolunbarri

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Bolúnbarri



*"... la casería rústica titulada Bolunbarri... situada en jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, en su barriada de Sarria, que comprende con inclusión de su horno y zaguan cuarenta y ocho estados cuadrados superficiales de planta solar, y la que se compone de una vivienda, con un piso y entresuelo..."*
*DJE, 1/133 or. (1864)*

*43° 11' 4"* *2° 36' 3"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Bizitza bateko baserri honen inguruko lehen aipu dokumentala 1865. urtean aurkitzen dugu, *Bolumbarri* (DJE, 1/ 133. or.), alegia, eta hortik aurrera, dokumentu guztietan izen bera agertzen zaigu. Baserriko eremura sartzeko atean "*Bolunbarri 1860-1995*" inskripzioa ikus dezakegu. Horren arabera, pentsa daiteke 1860. urtea baserriaren eraikitze-datarekin bat datorrela, eta 1995ekoa azkeneko zaharberritzearen data dela. Egun, beste zaharberritze-fase batean murgildurik dago, bizitza bateko baserria izatetik bizitza biko baserrira pasatzeko, hain zuzen ere.

Etxe ederra, zaharberritze lanak izanda ere, bere jatorrizko egitura gorde duena. Gainera, bat datorrena ate-aldean dagoen inskripzioko datarekin, XIX. mendeko itxura guztia dauka eta. Bi isuritako teilatupean hiru solairu nabarmentzen dira eta bere baoak hiru ardatzen arabera antolatu. Behekoan, ate dintelduna eta alboetan, leiho bana. Lehenengo solairuan, azpikoekin lerrokatuta, beste bana. Eta ganbaran, balkoi luzea, hiru baoak elkartuz eta horizontaltasuna emanez fatxadari, goranzko tendentzia apurtuz. Horma guztiak luzituta daude, kontraste ederra eginaz ate, leiho eta ertzetako harlanduen kolore gorrixkarekin.

## toponimia

*Izen bitxia da* Bolunbarri *baina kasu honetan, gure ustez, litekeena da bertako leku-izena ez izatea. Izenaren osagaiak argiak dira, bolu hitza, "errota", konposatuetan* bolun *bihurtzen dena eta* barri. Bolu *hitza latineko* molinum-*etik dator, gaztelaniazko* molino *bezala, eta euskaraz* bolinu *bihurtu eta gero* bolu *bihurtu zen. Nahiko erabilia izan zen garai batean, eta adibidez, hurbil dugu* Bolibar *ezaguna, gaur egun* Errotaibar *deituko genukeena. Kontua da* bolu *hitza aspaldian utzi zela bizkaieraz eta, esaterako, Getxon badago errota bat honela ageri dena XX. mendeko aipu batean:* "El molino harinero Bolunzarreta conocido mas generalmente por Errotabarri". *Ikus daitekeen bezala jendeak ez zuen ulertzen* Bolunzarreta *zer zen. Horregatik, kontuan hartuta* Bolunbarri *hau 1860koa zela eta Markina-Xemeinen badagoela horrela deitzen den etxea uste dugu handik etorritakoek jarritako izena dela seguru asko horrela esaten zitzaielako.*



# Bolunbarriburu

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa:



*43° 11' 4"* *2° 36' 4"* *Berriz Irudítan / J.A. Ramos*

*Bolunbarri* baserriaren eremuan egindako etxebizitza berria. 1972. urtean, *Bolunbarri* baserriaren etxea eta jabetzak banatzeko orduan, "*bolunaurre*" lursailean eraikitako etxe txikia. Kontuan izanda *Bolunbarri* etxearen goialdean kokatzen dela eraikina, *Bolunbarriburu* izena hartu du etxe honek. Egun berritze lanetan murgilduta dago.

Sasoi batean eraikin gehigarria izan zena, gaur egun, txalet bihurtzeko prozesuan dago. Isuri biko teilatuaren azpian, pisu bakarra eta ganbara antzematen dira, mantsarda eta guzti. Aldameneko fatxadan aterpea atxiki diote.

toponimia

*Munduan oso arrunta da gorputzaren zatiak lekuak izendatzeko erabiltzea, eta ezbairik gabe arruntena edo arruntenetakoa* burua *da. Euskal toponimoetan bi kasutan ageri da* buru *hitza. Batez ere leku baten gainean dagoen mendixka izendatzeko, baina inoiz ibaiek egiten dituzten meandroak izendatzeko ere erabili izan dugu eta hori bide da, esaterako, Zallako* Bolunburu *izenaren kasua. Hemen aldiz,* Bolunbarri *baserriaren goiko partean kokatzen den eraikina izendatzen du.*

# Bolungarai

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Bolúngarai / Bolóngarai



43° 11' 34" 2° 36' 15" *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*"... la casería rústica titulada Bolungaray...situada en la barriada de Sarria jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende con inclusión de su antusano tres mil setecientos treinta y un pies equivalentes a doscientos noventa metros veinte y tres centímetros de cabida, y la que se comprende de piso llano con zaguan, cocina y cuadras, de piso principal, con sala y pajar..."*
*DJE, 2/160 or. (1868)*

Bizitza bakarreko baserri honen inguruko lehen aztarnak 1666koa da, *Bolungaray* (BAHP, A419/32.), hain zuzen ere, eta bertan, Sarria aldeko baserri bati erreferentzia egiten zaio. XVIII. mendeko Bizkaiko su-erroldetan ere jasotzen da baserri hau: *Bolungarri* izenez 1704koan, *Volungaray* 1745ekoan eta *Bolungaray* 1796koan. Azken era hori mantenduko da XIX. eta XX. mendean zehar. Auzotarren artean, ahozko erabilpenari erreparatuta, *Bolúngarai* eta *Bolóngarai* formak aurkitzen ditugu.

Berritutako etxe zaharra, zeharo aldatutakoa 1994. urtean obrak egin zituztenean, zurezko atartea, teilatu-hegal zabala eta horri eusteko aldamenetako besoak baino ez zituztelako gorde. Nahiz eta alboan eraikina handitzen den, etxearen fatxada nagusia teilatuko gailurraren inguruan antolatu zen, horrek egiten baitu simetria-ardatz lana, oso ondo lortutako efektuari esker. Antolamendua sinplea da: jatorrizko atea, alde batean, eta leiho bi, ondoan; goiko pisuetan, balkoi luze batek bi baoak lotzen ditu. Fatxadak zarpiatuta eta zuriz pintatuta daude, eta harria erabili zuten kantaletan eta baoen ertzetan. Armarri berria du, eta inskripzio batek dio: "*BOLUNGARAI" / DUÑABEITIA TA IRAETAK / 1994AN BERRIZTATUA.*"

## toponimia

*Mendebaldeko Euskal Herrian* errota *deitzen dugun eraikuntza lehenago* bolu *edo* boli*, deitzen den eta nonahi ikus dezakegu hitz honekin osatutako toponimoak:* Bolibar, Bolueta, Bolunburu... *Hitz biek,* errota *eta* bolu*, latin jatorria dute. Latineko* rota *hitzetik* errota *sortu zen euskaraz eta* rueda *gaztelaniaz. Modu berean latineko* molinum*-etik gaztelaniazko* molino *eta euskarazko* bolu *sortu ziren. Antzina hitz honek* -n- *zuen,* bolinu*, baina euskaraz zenbait hitzetan bokalen artean ageri zen -n- soinu hori galdu egiten zen. Hori gertatzen zen bai leku izenetan (*Otxandio, Zestoa...*), bai euskarazko hitzetan (*ardoa, gazta*) baita latinetik hartutakoetan ere (*katea *eta* kanpai *latineko catena eta* campanatik*). Baina hitz konposatuetan berriro ageri da* -n- *hori eta horregatik esaten da* katenbegi, kanpandorre, ardandegi *eta* gaztanbera*.* Boluren *kasuan ere horregatik ageri da hemen edo* Bolunburu *izenean* n *hori. Beraz "*Errota garai*" esango genuke gaur* Bolungarai*-ren ordez.*



# Bolunzar

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Bolúnsar

*"... la casería molino titulado Bolunzar...situada en la barriada de Sarria jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende con su zaguan, huerta, antepara y estalde doscientos ochenta y nueve estados equivalentes a mil noventa y nueve metros cuadrados superficiales de cabida, y la que se compone de piso bajo, con una vivienda a manera de entresuelo y de camarote..."*
*DJE, 2/88 or. (1867)*



*43° 11' 6"* *2° 36' 2"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*Bolunzar* errotaren inguruko lehen aipu dokumentala 1704koa da, eta Bizkaiko su-erroldetan Sarria kofradiaren baitan agertzen den baserri / errota bati erreferentzia egiten dio: *Bolunzar*. Bigarren su-erroldan (1745ean), agiri guztietan *V* hizkiaz idatzita agertu arren, *B* hizkiaz idatzita ageri zaigu: *Bolúnzar* (1859, BUA, Nmcr.), *Bolunzar* (1867, DJE, 2/ 88. or.) eta 1967ko azken Udal-erroldan, *Bolunzar* (BUA, CE.).

Etxeari erreparatuz gero, nahiz eta elkarren ondoko bi eraikin moduan agertu bakoitza berezko bi isurkitako teilatu eta guzti, bistan da eraikin nagusia zein den, haren bi ertzetako harlanduek ondo frogatzen duten moduan. Ondokoa biltegia izan zen, eta harlanduak bakarrik alde batean ditu, beranduago egin zutenaren seinale. Errota izandako eraikinak XIX. mende inguruan handitutako egitura garbi bat du: hiru solairu eta baoak, hiru ardatzetan antolatuta, erdikoa nabarmenena izanik. Horregatik dugu behekoan sarrerako atea, gainean balkoia, eta ganbaran, balkoi luzea. Balkoiak horizontaltasuna ematen dio, eta bertikaltasuna hautsi. XX. mendeko berriztatze-lanetan harlangaitzezko hormak desestali zizkioten. Azpimarratzekoa da ateetako eta leihoetako buruak egurrezkoak direla, jatorrian etxe aberatsa ez izanaren seinale.

toponimia

Bolu *hitzak* errota *esan gura zuen euskaraz baina gaur egun ez da erabiltzen leku izenetatik kanpo. Gaur egun* Errotazar *esango genuke. Hitz hau, hala ere, oso erabilia izan zen eta hor dugu, esaterako,* Bolibar *"errotaren ibarra" edo* Bolunburu, *Markina-Xemiengo baserria eta Zallako dorretxe eta errota. Hitza latinetik hartu zuen euskarak, gaztelaniak bezala:* molinum > molinu > bolinu > bolu*. Konposantuetan ageri de* -n (Bolunzarra, Bolunburu) *antzinako* -n-*ren oihartzuna da. Euskaraz -n- hori desagertu den hitzetan berragertzen da konposatuetan, eta gazta,* katea *eta* kanpaia *esan arren,* gaztanbera, katenbegi *eta* kanpandorre *esaten dugu. Izenaren osagaiak argiak dira* bolu *hitza, esan bezala konposatuetan* bolun *bihurtzen dena "errota" eta* zahar*:* Errotazaharra*.* Bolunbarri sarreran adierazi dugun bezala (**Ikus Bolunbarri**) latineko molinum-etik hartu genuen euskaldunok bolu hitza bana *gero alde batera utzi eta* errota *(latineko* rota-*etik, gaztelaniaz* rueda*) erabiltzen dugu mendebaldean (beste hainbat lekutan* eihera *erabiltzen da).*

# Bolunzarburu etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa:



*43° 11' 7"* *2° 36' 4"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*Bolunzar* baserriaren "*solobarri*" lursailean eginda. Aipatutako errota honen goialdean kokatzen denez, bidearen bestealdean, *Bolunzarburu* izena hartu du eraikin honek.

Etxe berria, gaur egungo txaleten antzera eraikitakoa, baina tradizio berrinterpretatua aintzat hartzen duena. Bolumen desberdinez osatuta dago eta nagusiena solairu birekin eratutakoa bada ere, behealde guztian erabilitako harriak eta alde batera luzatutako teilatu hegalak, aterpeak osatzeko, batasuna ematen diote.

Bolumen nagusia, lehen esan moduan, pisu bikoa da eta bereziena du materialen konbinazioa. Hala, harria eta horma luzituak lehenengo pisuan ezker eskuman ditu. Gainera, harrizko aldean, leiho bana du pisuko, ondo lerrokatuta, eta luzitutakoan balkoi luzea, egurrezko mentsulen gainean eta burdinazko karel modernoduna. Egurraren erabilera ere bistakoa da. Bao ertz guztiak horrelakoak dira, teilatuaren armadura eta aterpeen zutikoak ere bai.

## toponimia

*Toponimo honen osagaiak* bolu *"errota"* zahar *eta* buru *dira. Esan bezala* (**Ikus Bolungarai**) *Bizkaian antzina* bolu *erabiltzen zen 'errota' esateko, baina hitz konposatuetan* bolun *ageri zaigu.* Buru *hitza oso arrunta da toponimian gaintxoak izendatzeko eta inoiz errekek egiten dituzten bihurguneetarako.*



# Errekaondo

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa:



*43° 10' 59"* *2° 35' 59"* *Berriz Irudi tan / J.A. Ramos*

2007. urtean eginiko etxebizitza dugu. *Erroteta* (**Ikus Erroteta**) baserri-errotaren lursailetan egin zen, eta *Arriaerrekaren* ondoan kokatzen denez, hortik datorkio izena.

Bizitza biko etxea da, *Errotetabarria* (**Ikus Errotetabarria**) izeneko etxearen oso antzekoa. Itxura simetrikoa du, alboetan etxe bakoitzak dituen teilapeak desberdinak diren arren. Hala ere, antolamendua garbia da. Erditik aldamenetara, beheko solairuan atarte ederra eta leihoa ditu. Horien gainean, balkoia eta beste leiho bat, atartearen zabalerako burdin sareaz bateratuak. Goialdean, egur-imitaziozko egitura bat dauka, eta tartean adreiluak, etxe zaharragoen tankerara. Hartara, azpimarratu behar dira egurrezko habeak, eta harria erabili izana ertz guztietarako, baita inposta gisa erabilitako plaka ere, solairuen arteko bereizketa egiteko. Horma guztiak pintatuta daude.

toponimia

*Izen gardena beste azalpenik behar ez duena.* Erreka *hitza antzina ez zen, gaur egun bezala, ura izendatzeko erabiltzen, horretarako* lats *erabiltzen baitzen. Garai horretan "haran txikia" edo horrelako zerbait esan nahi zuen. Gure errekak nahiko xumeak direnez azkenean inguru fisikoa izendatzeko hitza (erreka) eta ura izendatzekoa (latsa) nahastu ziren. Gaur egun Euskal Herriko ekialdean nahiko arrunta da* Latsa *izeneko errekak egotea.*





# Errekatxu

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa:



*43° 11' 16"* *2° 35' 45"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Inguruan duen *Sarriugarte* (**Ikus Sarriugarte**) baserriaren lursailetan dago eraikia bizitza biko etxe berri hau, Karkamo errekaren inguruan. Kontuan izanda Andikoatik igarota Oizetik datorren ubide horrek emari txikia duela, *Errekatxu* izena jarri diote eraikinari.

XX. mende amaierako eraikuntza da. Euskal Herriko hegoaldean aipatutako mende horren azkenean asko hedatu zen euskal landatar estiloan taxutua. Bi isurkitako teilatua du, eta oso modu simetrikoan antolatu zen fatxada nagusia. Aldamenetako gorputza ezik, beheko solairukoa goikoaren berdina da, hau da, erditik alborantz atea eta leihoa ditu. Bien arteko desberdintasuna dugu gaineko balkoi luzea, bizitza biko etxeari batasuna ere ematen diona. Fatxada zuriak kontraste handia egiten du pertsiana ilunekin eta goialdeko imitaziozko zurajearekin

toponimia

*Izen gardena bestelako azalpenik behar ez duena. Hala ere komeni da* erreka *hitzaz* Errekaondo *sarreran esandakoa irakurtzea.*



# Errotatxu

etxebizitza

Aldaerak: Astola / Errotarin
Ahozkoa: Erròtatxo / Erròtatxu / Urréjolana

*"... la casería rústica titulada Astola digo que es Molino llamado Errotachu,... radicante en el barrio de Sarria jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que ocupa una planta de cincuenta y tres estados superficiales, o ciento sesenta y tres metros cuadrados..."*
*DJE, 1/27 or. (1863)*



*43° 11' 19"* *2° 36' 5"* *Berriz Irudìtan / J.A. Ramos*

Egun erorita dagoen errota honen inguruko lehen aipu dokumentala XVIII. mendearen erdialdean egindako su-erroldan aurkitzen dugu: *Errotachu* (1745). Mendeetan zehar agirietan izen berarekin mantendu da, 1863ko jabego-eskrituretan izan ezik, bertan *Astola* izena ere aurkitzen baitugu: *"... la casería rústica titulada Astola digo que es Molino llamado Errotachu,..."*. XX. mendeko aipuetan azken izen hori aurkitzen dugu, hots, *Errotachu* (1967, BUA, CE). Dena den, 2010. urtean Gerediaga Elkarteak martxan jarritako "*Baserriak* on-line" datu-basean *Errotarin* moduan agertzen da. Ez dakigu nondik datorren izena.

Aurri egoeran dagoen eraikina izan arren, harlangaitzezko horma sendoek zutik diraute oraindik, harlanduzko kantalak eta leiho ertzak bezala.

Bada gertu *Errotatxu* izeneko beste eraikin bat, 1903an egin zutena, argindarraren enpresarentzako. Garai hartako arkitektura industrialaren arabera burutu zen, material xumeekin baina ondo luzituta. Beheko solairuaren nagusitasuna igartzen da leihoei emandako tratamenduan, hau da, neurrian, forman eta molduretan. Solairuen banaketan eta etxearen kantaletan ere, moldurak egin zizkioten. Binaka elkartutako leihoei esker, ondo argiztatutako etxea da.

toponimia

*Izen gardena "errota txikia" adiera duelako. Hori bai Bizkaian ohikoa den -txu txikigarriarekin, ez ohikoa den -txo. 1745ean ageri bada ere litekeena da lehenago beste izen bat izatea, baina hori teoria hutsa da.* Errota *hitza latineko* rota-*tik atera genuen euskaldunok. Berez* errota *garia ehotzen zuen harria zen, baina gero lantegia izendatzeko zabaldu zen. Gaztelaniaz latineko hitz honek* rueda *eman du*

# Errotabarria (-a) etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Errotabárri / Erótabárri



43° 11' 14" 2° 36' 3" Berriz Irudiitan / J.A. Ramos

*"...una casa molino conocida con el nombre de Errotabarria...en jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz... ocupa una planta solar, incluso un trocito de antusano de cuarenta y ocho estados o sean ciento ochenta y tres metros, se compone su piso bajo de zaguan, cocina, sala de molienda, cuadra y tejabana, el principal de tres dormitorios y saleta, y el resto desban..."*
*DJE, 4/34 or. (1878)*

*"...su maquinaria consta de dos piedras de moler, una de ellas de pan y otra de maiz con sus rodetes, ejes toldos pesebres y adherentes. La presa es de piedra, también el cuerpo de antepara..."*
*DJE, 4/34 or. (1878)*

Baserri honen inguruan aurkitzen dugun lehendabiziko aipu dokumentala 1704koa da, Bizkaiko su-erroldetan Sarrian dauden erroten artean *Errotabarria* aurkitzen baitugu. Hortik aurrera, mendeetan zehar izenforma bera mantendu izan da inongo aldaketarik gabe, eta, horrela, 1967ko Udal-erroldan, *Errotabarri* aurkitzen dugu.

Gaur egun, bizitza bikoa den baserri hau errota izandakoa da, izenak eta inskripzio batek argi uzten duten moduan. Fatxadetako baoak eta materialek ondo baino hobeto islatzen dituzte bertan egindako eraberritzeak. Argi esan genezake fatxadak luziturik eta pintatuta izango zituela, kontrastea eginez etxe-kantaletako, atarteko eta leiho bihurtutako atearen harlandu gorrixkarekin. Beste leihoek zurezko dintela dute, beste errota batzuetan ikusten den eran. Zaharragoa den arren, 1827an eta 2000. urtean berriztatu zuten, hasierako obretan harria erabili zutelarik. Atarte ondoko plaka batean honako hau irakur daiteke, mesedetakoen ezkutuaren albo banatan: "*ERROTA/ BARRIA/ BARRISTAUBA/ 1827/ GARREN URTIAN*". Kantal batean, berriz, lauburuaren azpian beste honako testu hau ageri zaigu: "*ERROTABARRI / 2000 / BERRI*".

toponimia

*Izen gardena, gardenik bada. Bizkaian antzina* bolu *hitza erabiltzen zen "errota" esateko eta horregatik* errota *hitzaz osatutako izenak berriagoak izaten dira.* Errota *hitza latineko* rota *hitzetik dator, gaztelaniazko* rueda *bezala.* Bolu *hitza ere latinetik zetorren* molinum-*etik gaztelaniazko* molino *bezala. Gogoan izan erromatar garaian errotak eskuz edo abereen indarrez mugitzen zirela eta erreka ondokoak berriagoak direla.*



# Errotetabarria (-a) etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa:



*43°11'0" 2°35'59" Berriz Irudìtan / J.A. Ramos*

2007. urtean eginiko etxebizitza. *Erroteta* (**Ikus Erroteta**) etxearen lurretan egin zen, eta hortik hartzen du izena.

Bizitza biko etxea dugu, *Errekaondo* (**Ikus Errekaondo**) etxearen oso antzekoa. Itxura simetrikoa du, alboetan etxeen teilapeak desberdinak diren arren. Hala ere, antolamendua garbia da. Erditik aldamenetara, beheko solairuan atarte ederra eta leihoa ditugu, eta horien gainean, balkoia eta leihoa, atartearen zabalera hartzen duen burdinazko sareaz bateratuak. Goialdean, imitazioko zurajea eta tartean adreiluak jarri zituzten, etxe zaharragoen tankerara. Hartara, azpimarratu behar dira egurrezko habeak, eta harriaz baliatzea ertz guztietarako, baita solairuen arteko bereizketa egiteko inposta gisa erabilitako plaka ere. Horma guztiak pintatuta daude.

toponimia

*Izen honetan* errota *hitz arrunta, euskaraz oso ohikoa den* -eta *atzizkia,* barria *atzizkia eta artikulua ditugu. Toponimian ageri den -eta atzizkiak bi esangura ditu, edo ugaritasuna (*Errota *hitza deklinatzean ageria da:* Errotetara, Errotetatik, Errotetan*) edo "lekua". Azken honen adibidea da, esaterako* Zubieta *herri ezaguna, zubi bakarra duena. Bizkaian antzina* bolu *hitza erabiltzen zen 'errota' esateko eta horregatik errota hitzaz osatutako toponimoak berriagoak izaten dira* bolu-z *osatutakoak baino.* Errota *hitza latineko rota hitzetik dator, gaztelaniazko* rueda *bezala.* Bolu *hitza ere latinetik zetorren* molinum-*etik gaztelaniazko* molino *bezala. Gogoan izan erromatar garaian errotak eskuz edo abereen bidez mugitzen zirela eta erreka ondokoak berriagoak direla.*

# Eskolak

hezkuntza eraikuntza

Aldaerak:
Ahozkoa:



*43°11'0"* *2°35'56"* *Berriz Irudita n / J.A. Ramos*

Berrizen, Euskal Herriko beste hainbat herritan bezala, auzo eskolak ere egon ziren. Bizkaiko Diputazioaren eraginpean eta udalen laguntzarekin, eskolak egiten hasi ziren XX. mende hasieran. Helburua argia zen: analfabetismo tasak jaistea eta, gainera, eskolak euskaraz ematen ziren.

*Antxinako Berriz. Bizimodua eta ohiturak* liburuan jasotzen den moduan, XX. mende hasieran hurrengo eskolak zeuden: Sarriakoa, Uribekoa eta bina eskolan Andikoan, Elizondon eta Olakuetan. Eraikin sinpleak izaten ziren, gela gutxirekin, ume denak elkarrekin, batera egoten zirelako. Beste gelaren bat izaten zuten, sukalde, jantoki edo biltegi moduan erabiltzeko, baita komunak eta su-egurra gordetzeko ere. Inguruko materialak erabiltzen ziren hauek eraikitzeko, hau da, harria eta egurra. Aterpea ere izaten zuten eskolari atxikita, Sarriakoan gertatzen den legez.

toponimia

*Eskola hitzaren ibilbidea oso deigarria da, Grekerazko hitza da eta hasieran "astia" edo "denbora librea" esan nahi zuen. Geroago astia zegoenean, hots lan egiten ez zenean, egiten zuena izendatzeko hasi zen erabiltzen eta azkenean ikasketa denbora izatera pasatu zen. Gero lekua izendatu zuen. Latinaren "erruz" zabaldu zen hitz hau mundu osora. XX. mendearen hasieran, purismo garaian, ikastola hitza hasi zen erabiltzen eta Bizkaiko Foru Aldundiak eraiki zuen auzo-eskoletan Escuelas de Barrio de Vizcaya / Bizkaya'ren Auzo-Ikastola ageri zen. Geroago, berriz, Ikastola hasi zen eskola euskaraz ematen zuen eskola izendatzeko. Ikastola hitza Sabino Aranari zor diogu, baina ez zuen ezerezetik sortu, Larramendik asmatutako ikastola hartu baitzuen.*



# Iturbe

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Ittúrbe / Ártabillena

*"... la casería rústica titulada Yturbe y su casa accesoria... situadas en la barriada de Sarria jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprenden juntamente con sus zaguanes y dos tejabanas trescientos setenta y ocho estados cuadrados superficiales de planta solar, y las que se componen de piso bajo y alto a manera de entresuelo, siendo la una de dos viviendas y la otra de una, con sus correspondientes cuadras y habitaciones..." DJE, 1/210 or. (1868)*



*43° 11' 27"* *2° 36' 5"* *Berriz Irudita n / J.A. Ramos*

Jausita dagoen baserribaserri honen gaineko lehen arrastoa XVIII. mende hasieran aurkitu dugu: *Yturbe* (1704, Bizkaiko su-erroldak). Dokumentazioan beti forma berarekin aurkitzen dugu erregistratuta: *Yturbe* (1825, PE eta 1866, DJE, 2/ 33. or.). 1967ko Udal-erroldan, berriz, *Iturbe* agertzen da, hasierako y grekoa i latinoarekin ordeztuta. Kasu batzuetan, *Ytúrbes* (1859,BUA, Nmcr.) izena aurkitzen dugu bertako etxeei erreferentzia egiteko. Izan ere, eremu horretan Iturbe etxeak hiru ziren: *Iturbe*, *Iturbeazpikoa* (**Ikus Iturbeazpikoa**) eta *Iturbegoitia* (**Ikus Iturbegoitia**). Auzotarren artean, ahozko transmisioan *Ittúrbe* eta *Ártabillena* izan dira erabilitako formak.

Egun sasi artean ezkutatuta dagoen arren, etxebizitza biko baserria XIX. mendeko tankeran eraiki zuten, bi isurkitako teilatuarekin. Harlangaitzezko hormak luzituta eta pintatuta izango zituen ziurrenik, kantal- eta leiho-ertzetako harlanduekin kontrastea eginez. Beste baserrietxe batzuen estiloan, ganbarako solairuan zurezko balkoia zeukan.

toponimia

*Izenaren osagaiak gardenak badira ere,* iturri *eta* behe, *ezin dugu hitz pare bat esan gabe utzi. Euskaraz oso ohikoa da iturri hitza duten izenetan itur agertzea eta horrela dokumentatzen da baserri hau ezagutzen dugunetik. Gainera sorrera XVI. mendean duen deitura ere* Iturbe *da eta honek esan gure du orduko* -i *hori desagertuta zegoela.* Iturbe *oso izen arrunta da eta horrela deitzen diren baserriak daude, edo egon dira, Aramaioko Barajuen auzoan, Araban; Dima, Elorrio, Igorre, Markina eta Zaldibarren Bizkaian eta Antzuola, Bergara, Ikaztegieta, Soraluze eta Urretxun Gipuzkoan. Guk dakigula ez dago ez Iparraldean ezta Nafarroan ere.* Behe *hitzaz ere badago zer esan. Kasu gehienetan* behekoa *bada ere Alfontso Irigoien zenak uste zuen izen zaharretan* txikia *ere esan nahi zuela.*





# Iturbeazpikoa etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa:



43° 11' 28" 2° 36' 7" Berriz Iruditan / J.A. Ramos

*"... la casería rústica titulada Yturbe y su casa accesoria... situadas en la barriada de Sarria jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprenden juntamente con sus zaguanes y dos tejabanas trescientos setenta y ocho estados cuadrados superficiales de planta solar, y las que se componen de piso bajo y alto a manera de entresuelo, siendo la una de dos viviendas y la otra de una, con sus correspondientes cuadras y habitaciones..."*
*DJE, 1/210 or. (1868)*

Errepidearen kontran kokatzen den baserri-etxe hau egun erdi-erorita dago, eta jatorrizko *Iturbe* (**Ikus Iturbe**) baserriaren alboko etxea edo eranskina zen. 1868ko eskritura batean horrela irakur daiteke (betiere, *Iturbe* baserriari erreferentzia eginez): "*... la casería rústica titulada Yturbe y su casa accesoria...*". *Iturbegoitia* (**Ikus Iturbegoitia**) baserriarekin gertatzen ez den bezala, etxe honen gaineko erreferentziak XVIII. mendekoak dira bakarrik: *Yturbe de Yuso* (1704, Bizkaiko su-erroldak), *Yturbe Beazcoa* (1723, BAHP, A258/30.), *Yturbe Veazcoa* (1773, BAHP, A421/1.) eta 1796ko su-erroldan agertzen zaigun *Yturbe Aspicoa*. Hortik aurrera, seguruenik *Iturbe* baserriarekin batera agertuko da loturik.

Nahiz eta handiena erorita egon eta fatxada nagusia desagertu den, eraikinak XIX. mendeko etxeen itxura du: bi solairu eta ganbara zituen; hormak harlangaitzezkoak ziren eta harlandua kantalen eta leihoen ertzak indartzeko erabili zuten.

## toponimia

*Izenak berak dioen bezala* Iturbe *etxe multzoan beheko aldean dagoen etxea. Bizkaian ohikoak dira auzo-izena+etxearen ezaugarria egitura duten izenak eta horregatik Bizkaikoak dira deiturarik luzeenak Euskal Herri osoan. Dokumentazio zaharrean* Iturbebeaskoa *moduan ageri da.* Beaskoa *eta* Azpikoa *gauza bera da, baina* Beaskoa (Goieaskoa *bezala) zaharragoa. Horregatik, nahiko arrunta da dokumentazio zaharrean* beaskoa *agertzea eta gaur egun* azpikoa *deitzea. Sarritan* beaskoa *baino zaharragoa den* beitia *ere agertzen da eta horregatik pentsa genezake XVII. mendean Abadiñon ageri den* Iturbebeitia *deitura hemendik sortu zela, goiko etxeari* Iturbegoitia *esaten baitzaio. Badirudi beasko hori behekotik sortu zela.*



# Iturbegana

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa:



*43° 11' 31"* *2° 35' 55"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Sarria auzoko goialdera doan bidearen erdian, XX. mende amaieran egindako bizitza bateko eraikin berri bat dugu, *Iturbegoitia* (**Ikus Iturbegoitia**) baserriaren gainean. *Iturbe* (**Ikus Iturbe**) baserriko familiarena izanik, etxeari izena jartzerakoan jabeek nahi izan zuten euren familia-baserriaren izenarekin lotura izaten jarraitzea, eta hortik datorkigu *Iturbegana* izena hautatzea.

Bolumenaren, materialen eta koloreen jokoa bistakoa da etxe honetan. Oso nabarmena da alboetako bi terraza estaliek eta teilatuko txapitulek etxearen gorputz simetrikoarekin eta trinkoarekin egiten duten haustura, baita beheko solairuko harriek egiten duten kontrastea ere, euren horma eta balaustre zuriekin. Hala ere, interesgarria da sarrera nagusia azpimarratzeko modua, erdian duen eskaileraren eta atartearen gaineko balkoiaren bitartez.

toponimia

*Izen gardena bestelako azalpenik behar ez duena. Hala eta guztiz ere nabarmendu behar da izen zaharretan ohikoa dela* iturri *hitzak azken silaba galtzea eta* itur- *bihurtzea kasu honetan bezala.*

# Iturbegoitia (-a) etxebizitza

Aldaerak: Txopena
Ahozkoa: Ittúrboti / Txopéna



43° 11' 30" 2° 36' 3" *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*"... la casería rústica titulada Yturbegoitia... situada en la barriada de Sarria... que comprende con su zaguan y horno ciento setenta y un estados cuadrados superficiales de planta solar, y la que se compone de una vivienda con piso bajo y alto a manera de entresuelo..."*
*DJE, 1/185 or. (1864)*

Bizitza biko baserri honen gaineko lehen aipu dokumentala XVII. mendearen erdialdekoa da, hots, *Yturbe Goitia* (1648, BAHP, A410/32.). Mendeetan zehar, izen horrek aldaketa gutxi jasan ditu, eta batzuetan banatuta idatzirik agertzen bada ere, XIX. mendetik aurrera ia guztietan batuta agertzen zaigu: *Yturbegoitia* (1789, BAHP, A317/4.), *Yturbegoyttia* (1792, BAHP, A486/33.), *Yturbegoitia* (1825, PE/1825.), *Yturve goiti* (1905, BUA, 40) eta 1967ko erroldan aurkitzen dugun *Iturbegoti*. Auzotarren artean, ahozko transmisioan *Ittúrboti* forma erabiltzen da. Bertakoek *Txopéna* ere esaten diote.

Etxe ederra dugu, ederrago oraindik eraberritu ondoren. XVIII. mendekotzat hartzen bada ere, XVII. mendean egiten zirenen antzekoa da, baina ezkerraldeko silarriak zaharragoaren adierazle dira. Azpimarragarria da eraikina hiru gorputzetan bereizita egotea, azkeneko erreformaren ostean bistan geratu den moduan, baita ondoan gehitutako aldea ere. Etxeak pisu bi eta ganbara ditu eta sarrera erdialdeko atarteak markatzen du, egurrezko dintelduna berau, egurrezkoak diren moduan leihoburu guztiak. Egin dioten erreforman baoak ordenatu eta modu bertsuan zabaldu dituzte, eta etxearen ganbara aldeko zurezko pareta zaharra ere kendu egin diote. Nabarmentzekoa da, halaber, kantal guztietan harlandua baliatu izana ertzak egiteko, harlangaitza erabili zutelako gainontzeko hormetarako eta arestian aipaturiko silarriak ezkerraldean. Materialekin bukatzeko, erdialdeko gorputzean ikusten denak *Lazpitagoikorekin* (**Ikus Lazpitagoikoa**) du lotura. Izan ere, dintelaren gainean harlangaitza dago eta honen gainean, zurezko egitura eta adreiluzko hormak aitatu behar ditugu, zeinetan zabaltzen diren leihoak. Isuri biko teilatua dauka.

## toponimia

*Izenak berak dioen bezala* Iturbe *etxe multzoan goiko aldean dagoen etxea. Bizkaian ohikoak dira auzo-izena+etxearen ezaugarria egitura duten izenak eta horregatik Bizkaikoak dira deiturarik luzeenak Euskal Herri osoan. Goitia "goikoa" zaharragoa da* goieaskoa *eta* goikoa *baino, eta sarritan (***Ikus Iturbeazpikoa***) batak bestea ordezkatu du.*



# Iturbeburu

etxebizitza

Aldaerak: **Artizar**
Ahozkoa:



*43° 11' 30"* *2° 35' 58"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*Iturbegoitia* (**Ikus Iturbegoitia**) eta *Iturbegana* (**Ikus Iturbegana**) etxeen artean kokatzen den eraikin berria. Etxe hau 1982. urtean eraiki zen, eta orduan , eraiki zenean *Iturbegana* txaleta oraindik egin barik zegoen. Bizitza bakarreko eraikin hau azken urteetan *Artizar* moduan ezagutua izan arren, jabeak prest agertu dira inguruko leku-izenekin bat datorren izena hautatzeko, eta hortik datorkigu *Iturbeburu* izena aukeratzearen erabakia.

Kontuan izanda ingurune horretan *Iturbe* izeneko baserriak egon zirela, zenbait dokumentutan zonalde hori *"Yturbes"* moduan izendatzen da. Beraz, Berriz aldean arrunta den *-buru* amaiera hori hartzea erabaki dugu, *Iturbe* (**Ikus Iturbe**) baserriaren goialdean kokatzen den etxe horri erreferentzia egiteko.

Bi isurkitako teilatupean, etxe moderno baten egitura sumatzen da, nahiz eta tradizioan etenik ez duen egiten, harrizko kantalak eta atarte erara itxuratutako sarrera egin zizkiotelako. Sarrera antolatzeko gailurra erabili zuten, baina fatxada nagusia guztiz asimetrikoa da lurretako aldatsa aprobetxatuz etxea alderik baxuenera hedatu zutelako. Albo batean leiho bat erantsi diote, eta baita beheko solairua ere.

toponimia

Iturbegana *kasuan bezala izen gardena da eta ez du bestelako azalpenik behar. Hala eta guztiz ere nabarmendu behar da izen zaharretan ohikoa dela* iturri *hitzak azken silaba galtzea eta* itur- *bihurtzea. Toponimian oso arrunta da hizkuntza guztietan gorputzaren zatiak erabiltzea eta denetan erabiliena* burua *da.*





# Lazpita

etxebizitza

Aldaerak: Lazpita erdikoa
Ahozkoa: Láspitte erdíkue / Láspittak



43° 11' 27" 2° 36' 16" Gerediaga Elkartea / Txelu Angoitia

*"... la casería rústica titulada Lazpita erdicoa y su accesoria...situadas en la cofradía o barriada de Sarria jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprenden con sus zaguanes y horno doscientos noventa y cuatro estados cuadrados superficiales de planta solar, y las que se componen de piso bajo y alto a manera de entresuelo con sus correspondientes viviendas, cuadras y habitaciones..." DJE, 1/201 or. (1866)*

Baserri honen gaineko lehen aipu dokumentala 1704koa da, urte horretako Bizkaiko su-erroldan *Laspita de Medio* aurkitzen dugu. XVIII. mendean zehar horrela agertzen bada ere, 1796ko su-erroldan *Laspita Erdicoa* moduan agertzen da. Hortik aurrera, izen horrekin mantendu da: *Lazpita erdicoa* (1826, BAHP, A194/15) eta *Lazpita Erdicoa* (1905, BUA, 40.). Dena den inguru honetako etxeak zenbait dokumentutan *Lazpita*s izenarekin agertzen dira, esate baterako Berrizko Udal-artxiboan gordetzen den 1859ko izendegian. Ahozko transmisioan ere *Láspitte erdíkue* eta *Láspittak* erabiltzen da auzotarren artean. Azken hori inguru horretako lau etxeei erreferentzia egiteko *Lazpita*, *Lazpitabekoa* (**Ikus Lazpitabekoa**), *Lazpitagoikoa* (**Ikus Lazpitagoikoa**) eta *Lazpitalarra* (**Ikus Lazpitalarra**) erabiltzen da.

Jausteko zorian dagoen baserri honek aspaldiko nekazaritza-etxeen taxuketa dauka, XVII. mendeko baserri batek baino gehiagok dutena. Nabarmentzekoak dira bi isurkitako teilatupean dauden bi gorputz handiak. Erdiko egurrezko dinteldun atarteak batasuna ematen dio, *Iturbegotia* (**Ikus Iturbegoitia**) baserrian egin den antzera. Azpimarratzekoa da ere harlandua baliatu izana beheko solairuan, leihoetan eta kantal guztietan ertzak egiteko; izan ere, harlangaitza erabili zuten gainontzeko hormetarako. Nabarmentzekoa da, era berean, gaineko solairuetan erabili zuten adreilua, egurrezko egituran txertatuta ageri zaiguna. Solairuen antolamendua, bestetik, ohikoa da: behekoa, lehena eta ganbara.

toponimia

*Zail da izen honi buruzko azalpen on bat ematea. 1704ko aipuan* Laspita *moduan ageri denez pentsa genezake aurreko osagaia* lats *"erreka" dela. Garai batean* latsa *esaten zitzaion urari eta* erreka *haranari, baina denborarekin* lats *hitza baztertu zen eta Bizkaian toponimian baino ez dugu aurkitzen. Hori horrela balitz,* lats+bi+ta *izan litekeela pentsa genezake, baina oso zalantzazkoa da etimo hau.*



# Lazpitabekoa (-a) etxebizitza

Aldaerak: Lazpitazpikoa / Lazpitabarrena
Ahozkoa: Láspitte békue



43° 11' 29" 2° 36' 17" Berriz Iruditan / J.A. Ramos

Jatorrizko *Lazpita* (**Ikus Lazpita**) baserriaren eranskina edo etxe-txikia omen zen egungo baserri-etxe hau. Fatxadan aurkitzen dugun inskripzioari erreparatuta, ikusten dugu baserri hau 1926. urtean eraiki zela: *"LAZPITA BARRENA/ FUE CONSTRUIDO/ POR/ D. JUAN LAZPITA/ Y/ D. CATALINA GANGOITIA/ AÑO 1926"*. Horrek ordura arteko dokumentazio guztiaren aipuak aldatzen baititu. Horrela, egungo *Lazpitaerdikoa*, data hori baino lehen *Lazpitabarrena* eta *Lazpitazpikoa* zen. Gauza bera gertatzen da Lazpitagoikoarekin, 1926. urtea baino lehen *Lazpitaerdikoa* izango baitzen, eta *Lazpitalarra* etxearen kasuan, *Lazpitagoikoa* izango zen izena.

Bi isurkitako teilatupean beste horrenbeste etxebizitza igartzen dira, fatxadari erreparatuz gero. Hala, antolamendua guztiz simetrikoa da, hiru solairutan eta ganbaran banatuta. Ardatz gisa ditu inskripzioa eta gailur azpiko leihoa. Etxearen beheko solairua harrizkoa da, harlangaitzaz egina, eta ondo markaturik dauzka tarte guztiak. Inposta-marra batek bereizten du gaineko solairuetatik. Hormak pintatuta daude, leihoen eta balkoien ertzak ez bezala, harlanduzkoak baitira. Bi solairuetan, erditik aldamenera, balkoia eta leihoa daude: lehenengoan, burdinazkoa; eta bigarrenean, egurrezkoa, bi baoak lotuz.

toponimia

*Euskaraz, denboran zehar, era asko egon da "beheko aldea" izendatzeko eta hori, askotan, etxe izenetan ikusten da aipu zaharrenetan egun erabiltzen ez diren* beitia *edo* beaskoa *moduko formak agertzen direlako. Kasu honetan XVIII. mendeko aipuetan* barren *dugu, 1905ean* azpikoa *eta gaur egun* bekoa *(***Ikus Lazpita***).*





# Lazpitagoikoa (-a) etxebizitza

Aldaerak: Lazpitagogeaskoa
Ahozkoa: Láspitte góikue



43°11'28" 2°36'17" Berriz Iruditan / J.A. Ramos

*"... la casería Lazpita-Gojeascoa y sus pertenecidos radicantes en jurisdicción de la anteiglesia de Berriz,...cita en la Cofradía de Sarria, es de una vivienda compuesta de piso bajo con cocina, cuarto portalada y cuadra principal con habitación, pajar y camaron; ocupa con la accesoria o arnaga de enfrente, el zaguan y una campa contigua doscientos cuarenta y medio estados, ó nueve áreas y quince centiáreas..."*
*DJE, 4/48 or. (1878)*

Bizitza bakarreko baserri honen inguruko lehen erreferentzia dokumentala Bizkaiko su-erroldetan aurkitzen dugu: 1704koan eta 1745ekoan *Laspita de Suso* agertzen da, eta, mende amaieran, berriz, *Lazpitagogeazcoa* (1781, BAHP, A26/3.). Hortik aurrera, izen horrekin ezagutu da *"Lazpitak"* izenez ezaguna den multzoaren goiko partean dagoen etxea: *Lazpitagojeascoa* (1863, DJE, 1/ 27. or.) eta 1967ko Udal-erroldan *Lazpita goxeascoa.* Auzotarren artean, *Láspitte góikue* moduan ezagutzen da.

Baserri handi honetan aldi desberdinetan egindakoaren arrastoak antzeman daitezke, hiru-lau mendetakoak, XVI. mendetik aurrerakoak, nahiz eta oinarrizko egituran *Lazpita* (**Ikus Lazpita**) edo *Iturbegoitia* (**Ikus Iturbegoitia**) baserrietako tankera ikusten den. Horregatik, bereizi behar ditugu aldamenetako bi gorputzak, oso kalitate onekoak. Harria erabili zuten ezkerraldeko leiho inguru guztietan, kantaletan, eskuma aldeko beheko solairuan eta alboetako fatxadetan. Eta erdian, aurreko biak elkartzeko, atartea, egurrezko dintelduna; egurrezkoa den moduan gaineko egitura guztia, konbinaturik harria (luzituta eta pintatuta egongo zena) eta gorengoko adreilua. Erdialdeko eta eskuma aldeko baoetan, harriaren ordez, egurra erabili zuten. Eta egurrezkoak dira fatxada nagusiko hiru balkoiak, teilatuaren hegal zabalaren babesean jasoak, bat eginaz habeekin eta hauei eusteko besoekin, etxeari simetrikotasuna, kolorea eta bolumen joko polita emanaz.

## toponimia

*Euskaraz, denboran zehar, era asko egon da "goiko aldea" izendatzeko eta hori, askotan, etxe izenetan ikusten da aipu zaharrenetan egun erabiltzen ez diren* goitia *edo* goieaskoa *moduko formak agertzen direlako. Kasu honetan XVIII. mendetik XX. mende arteko aipuetan goiaskoa dugu, nahiz eta gaur egun goikoa esan.* Goieaskoa *eta* beaskoa *hitzak oso erabiliak izan ziren eta badirudi osagaiak* goiko *eta* be(he)ko *direla tartean indarra emateko* as *hizkia dutela (***Ikus Lazpita***).*



# Lazpitalarra

etxebizitza

Aldaerak: Kapelena
Ahozkoa:

*"... la casería rústica titulada Lazpita larra... situada en la barriada de Sarria, jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz que comprende con su zaguan ciento ocho estados cuadrados superficiales de planta solar, y la que se compone de dos viviendas, con piso bajo y otro alto a manera de entresuelo..."*
*DJE, 2/84 or. (1867)*



*43° 11' 18"* *2° 36' 20"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Garai bidean dagoen baserri honen gaineko lehen aipamena 1704ko Bizkaiko su-erroldetan aurkitzen dugu: *Laspita Larra*. Izenak aldaera gutxi jasan ditu mendeetan zehar. Lehenbiziko su-erroldetan bananduta agertzen bada ere, gerora bi formak txandakatzen dira (banandua eta elkartua), eta batez ere, XX. mendean zehar, elkartuta agertzen da idatzirik: *Laspitalarra* (1825, PE/1825.), *Lazpita larra* (1865, DJE, 1/133. or.) eta *Lazpitarra* (1910, BUA, RU.). Berriztarren artean, *Kapelena* izenez ere ezagutzen da. Dirudienez, lehengo jabeetako batek ohitura zuen kapelarekin ibiltzeko, eta hortik datorkio ezizena.

Etxeak XVIII. mendeko baserrien itxura du; baina teilatuaren gailurra ez dago ardatzean, eta hori beranduago obrak egin izanaren adierazlea izan daiteke, agian, bizitza bikoa bihurtzeko egin ziren lanen garaikoa. Dena dela, jatorrizko eskema sinplea da. Bi isurkitako teilatua du, eta fatxada hiru ardatzetan antolatu zuten. Erdian, sarrerako arku bikaina zeukan, atarte zabalera sartzeko, eta gainean, balkoia. Azken hori ere beranduago jaso zuten, hormigoiak garbi uzten duen moduan. Aldamenetan, leiho bana dauka, solairu bakoitzean.

toponimia

Lazpita *izenaz eta* larra *hitzaz osatutako etxe izena. Antzina larrak oso ugariak ziren gurean eta behar beharrezkoak baserrien bizitzarako abereen bazka eta egur eta zura lortzen zelako, besteak beste, baina denborarekin etxeak eraiki ziren izatez irekiak izan ziren inguru horietan, kasu honetan bezala*



# Mugaburu

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa:



*43° 10' 54"* *2° 36' 17"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Abadiñoko Gerediaga auzotik Garairantz doan bidearen ondoan kokatzen den bizitza bateko txalet berria. Errepide horretako zenbait momentutan Berrizen eta Garairen arteko muga markatzen da, eta, muga inguruan egonda, *Mugaburu* izena hartu zuen eraikinak. Atartean *"2002. urtea"* inskripzioa du jarrita, eta goialdean agertzen den balkoiaren gainean, aldiz, *"MUGABURU"* izena agertzen da.

Etxe berria, inguruko tradizioari keinu bat baino gehiago eginaz egiten ari direna. Hau da, bi isuritako teilatua eta hegal zabalekoa, beso handiek eusten diotena. Fatxada hiru ardatzen arabera eratu dute. Erdian, sarrerako arkua, gaineko balkoi sakona, egurrezko dintelduna, izena rekin, eta teilatupean, puntu erdiko leiho bikoitza. Aldamenetan, egurrezko besoek bereizita, leiho txiki bana. Alboko ardatzetan, leiho bana. Fatxadan, aipatutako egurraz gain, adreilua erabili dute eta harria, bao guztiak inguratzeko, aldamenetako leihoburuak izan ezik.

toponimia

*Eraiki berria den etxe honek bertako ezaugarria hartu zuen izen moduan Euskal Herriko ohiturari jarraiki.*



*Nuévo Nomenclátor*

*Provincia de Vizcaya* *Partido judicial de Durango*

*Ayuntamiento de Verriz*

| Nombres de las poblaciones y viviendas | Clase de las mismas | Distancia a la cabeza del Ayuntamiento |
|---|---|---|
| *Árria* | *Molino y casa de labor* | *5,555 metros* |
| *Bolungaráy* | *Casa de labor* | *5 kilometros* |
| *Bolúnzar* | *Molino* | *2,900 metros* |
| *Errotabarría* | *Molino* | *3 kilometros* |
| *Errotáchu* | *Molino* | *3,100 metros* |
| *Ytúrbes* | *Casas de labor* | *3,800 metros* |
| *Lazpítas* | *Casas de labor* | *3,800 metros* |
| *Oiz* | *Casa de labor y cortijos* | *10 kilometros* |
| *Sárria* | *Casa de labor* | *3,700 metros* |
| *Sarri-Ugárte* | *Casa de labor* | *3 kilometros* |
| *Sarri-Urízar* | *Casa de labor* | *5 kilometros* |
| *Ubillas* | *Casas de labor* | *4,500 metros* |
| *Ugartebidéas* | *Casas de labor* | *3 kilometros* |
| *Ugarteco-erroteá* | *Molino* | *2,800 metros* |

*BUA / Udal izendegia, 1859.*

# Oizko etxeak

Aldaerak:
Ahozkoa: Óixko etxíek




*BUA / Mapa topografikoa, 1933*

Oiz mendiaren hegoaldeko magalean kokaturiko baserri-etxeak dira honako hauek. Urte askotan zehar erabili izan dira, eta XIX. mendetik dokumentatuta daude. Guztira, hiru etxe aurkitzen ditugu, eta kokapenaren arabera bereizten dira: *Oizgoikoa, Oizerdikoa* eta *Oizazpikoa.* Zenbait erroldatan, 1825. urteko polizia-erroldan, esaterako, *Oiz* moduan agertu izan dira, eta, beste batzuetan, aldiz, bereizten dira.

Ezaugarriei dagokienez, tamaina apaleko baserri etxeak dira. Oina laukizuzena dute, eta teilatuak bi isurkitakoak dira, harlanduzko dinteldun baoekin eta manposteriazko harriaz egindakoak.

toponimia

*Durangaldeko mendirik esanguratsuena da Oiz eta bere etimoa dela eta, asko idatzi izan da. Nafarroan ere bada Oiz izeneko herria, Malerrekan, eta inoiz idatzi izan da etimoa izan litekeela jabetza adierazten duen -iz amaiera eta -O petsona izena, baina zaila da, edo ezinezko, etimo hori mendi bati ematea. Kasu honetan izenen bigarren zatia kokapenarekin erlazionatuta dago (*azpikoa, erdikoa *eta* goikoa*) eta zonalde zehatz batean kokaturiko baserria dela errefentzia egiteko erabili izango zen.*



# Oizazpikoa

*"... la casa rustica titulada Oizazpicoa... situada en el término de Oizazpicoa jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz que comprende con su accesoria y tejabanas y horno cincuenta y dos estados, equivalentes a ciento noventa y siete metros cuadrados superficiales de cabida,... y la que se compone de dos pisos bajo y alto y desban, con sus correspondientes cuadras, divisiones y habitaciones..."*
*DJE, 2/17 or. (1866)*



*43°12'42"* *2°35'56"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Etxe honen gaineko erreferentziak XIX. mendearen erdialdean aurkitzen ditugu, bertan gaztelaniazko forma zein euskarazkoa erabiltzen delarik: *Oiz de abajo* (1866, DJE, 2/ 14. or.) eta *Oiz azpicoa* (1866, DJE, 2/ 17. or.).

Hiruretatik txikiena da. Etxe apala dugu, bizi izateko erosotasun handirik eskainiko ez zuena, leiho ezak adierazten duen moduan. Bestalde, XIX. mendeko etxe askoren antzekoa da: bi isurkitako teilatua, harrizko dintela duen atearekin, kantaletan harlanduak eta harlangaitzaz jasoa.

# Oizerdikoa



43°12'41" 2°35'56" Berriz Iruditan / J.A. Ramos

*"... la casa rústica titulada Oizerdicoa... situada en el termino de Oiz jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende con su accesoria y tejabanas sesenta y seis estados, equivalentes a doscientos ochenta y nueve metros cuadrados superficiales de planta solar... y la que se compone de dos pisos bajo, alto y desvan, con sus correspondientes cuadras, divisiones y habitaciones..."*
*DJE, 2/44 or. (1866)*

Baserri etxe hau XVIII. mende amaieratik aurrera eta XX. mende hasierara arte egin zirenen estilokoa da, baina, leihoen neurria ikusita, hurbilago edukiko zuen lehenengo data bigarrena baino. Bi isuritako teilatua, harrizko ateburua duena albo batean, leihoa, beste aldean, eta goiko solairuan, bi leiho. Harlangaitzaz jaso bazuten ere, kantaletako harlanduak eta bao ertzetakoak oso ederrak dira.



# Oizgoikoa

*"... la casa rústica titulada Oizgoicoa... situada en el coto redondo de Oiz jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende con sus tejabanas [accesorias] noventa y cinco estados, equivalentes a trescientos sesenta y un metros cuadrados superficiales de planta solar... se compone de piso bajo y alto y desban, con sus correspondientes cuadras, divisiones y habitaciones..."*
*DJE, 2/11 or. (1866)*



*43°12'38" 2°35'54" Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Azken hau XX. mende hasieran *Oizetxebarria* moduan agertzen da dokumentatuta: *Oiz-echevarria* (1905, DJE, 7/ 177. or.). Berriztarren artean, *Óixkoetxebarri*, *Óizetxebarriéta* eta *Óizko etxébarrieta* erak erabiliak izan dira, baina gehienbat *Óixko etxíek* moduan ezagutzen dira.

Hiruretatik, handiena da eta XVIII. mendeko etxeen itxura dauka. Teilatua, bi isuritakoa, solairu bi eta ganbara. Atartera sartzeko arku ederra dauka fatxadaren erdi-erdian. Eta ardatza indartzeko, gainean, leihoa. Aldamenetan, solairu bakoitzean, leiho bana. Harlangaitza erabili zuten hormak egiteko eta harlandua, kantaletan, arkuan eta leiho ertz guztietan. Gainera, ardientzako leku aproposa gehitu zioten alboan, eta aurreko teilapean, labea.

# Patala

etxebizitza

Aldaerak: Makiñetxea / Zentrala
Ahozkoa: Makiñetxie / Patála



43° 11' 38" 2° 36' 19" *Gerediaga Elkartea / T.Angoitia*

Argindarra ekoizteko egindako zentral hidroelektrikoa da, 1900. inguruan, energia mota hori zabaltzen hasi zenean industria eta garraiobide berrien premiak asetzeko. Gaur egun bizirik dirauen bakarra da, bere inguruko denak desagertu egin baitira. Zentrala bi momentutan egindakoa da. Hasierakoak dira turbina eta generadoreentzako gunea eta administraziorako pentsatua. Eta 1950ean transformadore eta goi-tentsioko gelaxkak gordetzeko egin zuten hirugarrena. Argazkian ikusten duguna administraziorako deitu duguna da, hots, bulego eta etxe izateko pentsatua. Eraikin soila da, simetria garbian jasoa. Harrizko zokaloaren gainekoa harlangaitzaz egin zuten, gero luzitu eta pintatzeko. Eta pisu bakoitzeko baoak ere hala dauzka, beste kolore bateko plaken bidez hornituta, etxearen kantalak bezala.

toponimia

*Euskal Herriko leku izenen artean arrunta ez den izen bat dugu honako hau. Berriz, eta oro har Durangaldean, erreferente izan den zentral hidroelektriko honek duen etimoari buruzko teoriarik ez dugu.*





# Sarria Baserriak




*BUA / Mapa topografikoa, 1933*

*toponimia*

Sarri *hitza oso ugaria da toponimian Euskal Herria osoan, nahiz eta beste kasu askotan bezala gaur egun toponimian duen adierarekin oso erabilia ez izan. Hitz honen adiera bi ditu, 'askotan' eta zuhaitz edo landare asko dagoen lekua, erdaraz "espesura". Inoiz idatzi da* sarri *izatez* sartu *aditzaren aldaera zaharra dela euskal aditz zaharrek* -n *edo* -i *amaiera dituzten bitartean (*izan, egon, ikusi, ibili...*) berriek* -tu *baitute. Berrizen aldiz sei kofradietatik zabalera handiena duenak Sarria izena du, eta bertan aurkitzen ditugu auzoaren izena barneratuta duten baserriak, hala, auzoaren izena dugu eta gero etxearena berarena:* Sarriamatza, Sarribeitia *(***Ikus Sarribeitia***),* Sarrionaindia *(***Ikus Sarrionaindia***),* Sarrigoitia *(***Ikus Sarrigoitia***),* Sarriortuzar *(***Ikus Sarriortuzar***),* Sarriogonbe *(***Ikus Sarriogonbe***),* Sarriugarte *(***Ikus Sarriugarte***) eta* Sarriurizar *(***Ikus Sarriurizar***).*

*Lehen kasu horretan, izenaren bigarren osagaia,* Amatza*, ilunagoa da, eta, itxuraz, "ama" eta ugaritasuna adierazten duen* -tza *atzizkia ditugu.*



# Sarriamatza (-a)

etxebizitza

Aldaerak: Amatza
Ahozkoa: Amátza

*"... la casería rústica titulada Sarri-amaza... situada en la barriada de Sarria jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende con inclusión de zaguan, horno y un poco de huerta, doscientos cuarenta y siete un estados, equivalentes a ochocientos cuarenta y un metros cuadrados superficiales de cabida, y la que se compone de dos viviendas, con piso bajo a manera de entresuelo y de alto..."*
*DJE, 2/92 or. (1867)*



*43° 11'25"* *2° 35'44"* *Gerediaga Elkartea / T. Angoitia*

Baserri honen gaineko lehen aipamena 1704ko Bizkaiko su-erroldetan aurkitzen dugu: *Zarriamasa*. Sarria kofradiaren goialdean aurkitzen den baserri bati erreferentzia egiten dio ageriak. XVIII. mendearen erdialdetik aurrera, hasierako *Z* hori *S*-rekin ordezten da dokumentu guztietan, eta aldaera bakarra agertuko da, jarraian idatzita edo bananduta: *Sarriamaza* (1771, BAHP, A277/1.), *Sarri-amaza* (1867, DJE, 2/ 92. or.), *Sarri Amaza* (1905, BUA, 40.) eta azken urteetan erabilitako forma, hau da, *Sarriamatza* (1967, BUA, CE.). Ahozko transmisioan, auzotarren artean *Amátza* edo *Mátza* formak erabiltzen dira.

Bizitza biko etxea, fatxadan ere igartzen dena. Bi isuritako teilatuaren azpian, eta arkuak eta gaineko leiho luzeak sortzen duten ardatzaren arabera, antolatzen dira bi aldeak, arrunt samarra den eskema batean. Beheko solairuan, leihoa; gainekoan, bina leiho; eta gorengoan, balkoi luzea, egurrezkoa, lotzen dituena leiho luzea eta izkinako txikiagoa, teilatuaren itxurari egokitzeko. Egun harlangaitza bistan badauka ere, bere garaian estalita eta margotuta izango zuen, kontrastea eginaz kantaletako, arkuaren eta leihoen harlanduekin. Tamaina kontuan izanda, XIX. mendean egindako etxea dela dirudi.





# Sarribeitia (-a) etxebizitza

Aldaerak: Beitia
Ahozkoa: Béiti



*43° 11' 24"* *2° 35' 45"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*"... la casería rústica titulada Sarriveitia...situada en la barriada de Sarria jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende ciento cincuenta y un estados, equivalentes a quinientos setenta y cinco metros de planta solar, y la que se compone de dos pisos alto y bajo, con sus correspondientes divisiones y habitaciones, siendo la cabida con inclusión de su horno y zaguan..."*
*DJE, 2/205 or. (1869)*

Sarria kofradian kokatzen dugun baserri honen gaineko lehen aipamen dokumentala 1745ekoa da, *Sarri Veytia* (Bizkaiko su-erroldak). Hortik aurrera, dokumentazioan forma bera mantendu izan du, *-beitia* batzuetan (gehienetan) *V* eta besteetan *B* hizkiaz idazten dela izanik alde bakarra: *Sarriveitia* (1784, BAHP, A206/33.), *Sarribeitia* (1803, BAHP, A84/9.), *Sarri Veitia* (1905, BUA, 40.) eta azkenengo Udal-erroldetan agertzen den *Sarribeitia* (1967). Auzotarren artean, baserri hau *Beitia* moduan ere ezagutzen da, eta ahozko transmisioan *Béiti* izan da erabilitako forma.

Berritutako baserria dugu, XVII. mendean zabaldutako estiloan beste zaharrago baten lekuan berreraikia. Bi isurkitako teilatudun etxea da, bi solairutan bananduta. Hiru gorputz bereizten dira: aldamenetakoak, harlanduzko kantalekin, eta erdian atartea, harrizko kantoien gainean ezarrita dauden egurrezko dintelak eutsitako solairuaren azpian. Baoak zabaldu dituzte, ohiko leihoak eta balkoiak jarrita, eta erabilitako materialetan, harria nagusi bada ere, lehenengo pisuko adreilua ere azpimarratzekoa da eta teilatupeko egurrezko zurajea eta horma luzitua ere bai. Zurajea aipatu dugu, horrek aspaldiko etxegintza gogora ekartzen baitigu. Horrela, tradizioan oinarrituta, ateak eta leihoburuak egurrezkoak egin zizkioten.



# Sarrigoitia (-a) etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Sarrígoiti

*"... la casería titulada Sarrigoitia, en el termino de la Anteiglesia de Berriz, en la cofradía de Sarria... de una vivienda, compuesta en el piso bajo de cocina, dos cuartos, y una cuadra, en el principal de cuartos, camarotes y pajares, teniendo al frente una accesoria conel antusano o zaguan, ocupa una superficie de doscientos cuarenta y seis estados, equivalentes a nueve áreas, treinta y seis centiáreas..."*
*DJE, 4/171 or. (1880*



*43° 11' 27"* *2° 35' 44"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Bizitza bakarreko baserri honen gainean aurkitzen dugun lehendabiziko aipu dokumentala 1704koa da, *Zarrigoitia*, alegia. Bizkaiko lehen su-errolda horretan Sarria kofradiaren goialdean kokatzen den baserriari erreferentzia egiteko erabiltzen da forma hori. Inguru honetan kokatzen diren baserriekin gertatzen den bezala, dokumentazioan jasan dituen aldaketa bakarrak dira: hasiera batean, *Z* hizkiaz agertzen da idatzia Sarria, *Zarrigoitia* erak erakusten duen bezala, eta gerora, aldaketa bakarrak dira batera idatzita agertzea, hots, *Sarrigoitia* (1857, BUA, Viv.), edo bananduta, hau da, *Sarri-Goitia* (1910, BUA, RU.). XX. mendearen erdialdetik aurrera, aipu gehienetan dena jarraian idatzita agertzen da, hots, *Sarrigoitia*. Ahozko transmisioan *Sarrígoiti* forma erabiltzen da.

Etxea berria da, baina XVII. mendeko etxeen antza dauka, Berriz inguruan sasoi horretan egin zirenen estiloan eraiki baitzuten. Etxe zaharrago baten harriak erabili zituzten, eta batean 1818ko data irakur daiteke. Bi gorputz dauzka aldamenetan, eta erdian, beste bat, egurrezko dintela duen atarte batekin. Aldameneko gorputzen beheko solairua harrizkoa da. Hormetarako harlangaitza erabili zuten, eta harlandua, ostera, alboko leihoetan eta kantal guztietan. Bigarren solairuan, berriz, fatxada luzitu eta pintatu egin zuten, kontraste handia eginaz alde horietako baoen harriaz eta erdiko leiho zabalaz. Alderik alde doan egurrezko balkoia dauka, etxeari horizontaltasuna ematen diona. Erdialdean, leihoaren gainean, imitazioko zurajea eta adreilua ditu, eta teilatuari eutsiz, egurrezko besoak.



# Sarriogonbe

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Ónbe



*43° 11' 25"* *2° 35' 41"* *Gerediaga Elkartea / T. Angoitia*

*"... una casa titulada Sarriorumbe que esta situada en la cofradía de Sarria de la anteiglesia de Berriz... consta de dos viviendas y se compone la vivienda del lado Nor-Oeste de zaguan, cocina y cuadra en el piso llano; en el principal tiene dos cuartos, camarote y pajar; la vivienda del lado sur se compone en el piso subterráneo de cuadra, en el piso llano de cocina, dos cuartos y tránsito, y en ell pisoprincipal dos cuartos y saleta, y en el resto camarote... mide su planta solar de doscientos sesenta y cuatro metros cuadrados..."*
*DJE, 6/147 or. (1893)*

*Sarriogonbe* baserriaren lehendabiziko aipu dokumentala Bizkaiko lehen su-erroldakoa da: *Obombe* (1704). Inguru honetako beste baserriekin gertatu ez bezala, baserri hau agirietan hainbat era desberdinekin topatzen dugu. XVIII. mendearen bigarren erdialdean *Sarriogumbe* (1789, BAHP, A416/4.) da formarik erabiliena; XIX. mendearen lehen laurdenetik aurrera, *Sarriogombe* (1825, PE/1825.) erabiltzen da nagusiki; eta XX. mendean sartuta, *Sarri Ombe* (1905, BUA, 40.) hasieran, gero *Sarri Orumbe* (1910, BUA, RU.), eta, azkenik, *Sarriombe* (1967, BUA, CE.) erak erabiltzen dira. Auzotarrek *Ónbe* era erabiltzen dute bereziki.

Baserria erorita dago, baina, oraindik dauden arrastoen arabera, antzeman daiteke zein izango zen bere itxura. Sarri ikusi dugun trazan eraiki zen: XVII. mendean zabaldu zenekoa, hiru gorpuzduna. Beheko solairuan, aldamenetakoak harlanduzko kantalak eta leiho ertzak dituztenak dira, eta erdian, atarte zabala. Berau egin ahal izateko, egurrezko dintela erabil zuten, harkantoiek eta egurrezko zutikoak eutsita. Bigarren solairuak, ostera, egurrezko egitura zuen, tarteak harlangaitz arinaz beteta. Eta ganbaran, egurrezko balkoi luzea, bi isuritako teilatuak sortzen zuen frontoian kokatua.



# Sarrionandia (-a) etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Ónaindi

*"... la casería titulada Sarrionandia en el termino de la anteiglesia de Berriz, en el barrio de Sarria... de una vivienda, ocupa una planta solar de noventa y tres estado, o sean cincuenta y tres metros incluso la superficie que ocupa el horno. Se halla distribuida en piso llano, alto o principal o desvan, el llano de compone de zaguan, cocina, cuatro dormitorios y cuadra. El piso principal, de sala, dos dormitorios, y el resto pajar..."*
*DJE, 4/128 or. (1879)*



*43° 11' 25"* *2° 35' 46"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Sarria kofradiako baserri honen gaineko lehen aipu dokumentala XVII. mendeko bigarren erdialdean aurkitzen dugu: *Sarria Onandia* (1672, BAHP, A1264/32.). Gerora, XVIII. mendearen hasieran, Bizkaiko lehendabiziko su-erroldetan *Zarrionandi* (1704) aurkitzen dugu. Lehendabiziko su-errolda horretan, Sarriako aipu guztiak *Z* hizkiz idatzirik agertzen dira. Berezitasun horretaz aparte, hortik aurrera aipu guztietan *Sarrionandia* dena jarraian eta S hizkiaz idatzirik agertzen da: *Sarrionandia* (1826) BAHP, A164/15.), *Sarrionandia* (1879, DJE, 4/ 128. or.) eta *Sarrionandia* (1967, BUA, CE.). Ahozko transmisioan, beste kasuetan bezala, *Sarria* baztertzen da, eta izenaren bigarren zatia baino ez da erabiltzen *Ónaindi*.

Aspaldiko baserri etxea, egituran dolarea zuena, orain dela lau bat mendetakoa, behintzat, fatxada nagusiak ondo baino hobeto adierazten duen moduan. Azkeneko berriztatze lanetan aldaketa batzuk egin badizkiote ere, orokorrean gorde du jatorrizko izaera. Azpimarratu beharko genituzke aldamenetako bi gorputzak, XVI. mendean erabiltzen ziren harlanduzko silarriekin eginak. Neurri oneko leiho bana zuten beheko solairuan eta gaur egun, goikoan ere bai. Eta erdiko gorputza, berriz, material xume eta arinagoekin egindakoa, atarte handiaren gainean eratua, eskumako bigarren solairuan ere ikus zitekeena. Atartearen zabalera salba-tzeko, egurrezko dintela zuen eta hari eusteko, zutikoa. Gaur egun, etxearen itxura guztiz bateratu dute, ongi bereiziz hiru gorputz edo atalak, bereziki indartuz erdialdekoa, oso kolorista bilakatu baitute, egurrezko egitura eta horma luzituak errekuperatuz eta zutoinak ere biderkatuz.



# Sarriortuzar etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Ortúsar



*43° 11' 26"* *2° 35' 45"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*"... la casería de Sarriortuzar y sus pertenecidos radicante en jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz...barriada de Sarria... es de una vivienda y consta de un piso bajo y otro alto con cocina, cuadra, camarotes y pajares... mide con inclusión de los zaguanes, huertas de enfrente parte zaguera, costado del poniente y una campita contigua con nogales nombrada Charrondo trescientos veinte y seis estados equivalentes a cinco áreas y cincuenta centiareas..."*
*DJE, 4/69 or. (1878)*

Baserri honen gaineko lehendabiziko aipu dokumentala 1605. urtean aurkitzen dugu: *Sarriorttuzar* (1605, BAHP, A835/32.). Handik ehun urtera, 1704ko Bizkaiko su-erroldan *Ortúzar* bezala agertzen zaigu baserri hau. Inguruko baserriekin gertatzen ez den bezala, kasu honetan ahozko era idatzizko era luzearekin tartekatuta agertzen da dokumentazioan: *Sarriortuzar* (1754, BAHP, A489/32.), *Ortuzar* (1825, PE/1825.), *Sarri Ortuzar* (1905, BUA, 40.) edota azken Udal-erroldetan erabilitako era, hots, *Sarriortuzar* (1967). Aipatu dugun moduan, ahozko transmisioan, beste kasuetan bezala, *Sarria* desagertu, eta izenaren bigarren zatia baino ez da erabiltzen *Ortúsar.*

Bizitza bakarreko etxe hau 1942an egindako berriztatze sakon baten ondorio da, fatxadako inskripzioak adierazi moduan. XIX. eta XX. mende hasieran egin ziren etxe askoren antzera, atartea aldamenean egin zioten, egurrezko dintelarekin eta harlanduarekin janbetan. Lehenengo solairuko hiru leiho eta balkoi bihurtutako baoaren ertzak ere material berarekin egin zituzten, baita azkeneko solairuko balkoia eta alboetako bi leihotxoen ertzak ere. Gainerako hormak harlangaitzez jaso zituzten. Lehenengo solairuko balkoiaren gaineko buruko inskripzioak honela dio: *"FUE REEDIFICADA POR/ FELIPE EGUREN Y CATALINA MAGUREGUI/ CONSORTES AÑO 1942/ SARRI-ORTUZAR N: 244".*



# Sarriugarte

etxebizitza

Aldaerak: Ugarte
Ahozkoa: Sarríugárte / Uhárte / Uhérte

*"... la casería rústica titulada Sarriugarte... situada en jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende con inclusión de su casa accesoria o arnaga, el horno y zaguan, doscientos siete estados, equivalentes a siete areas y ochenta centiareas de cabida, y la que se compone de dos viviendas, con sus correspondientes pisos, divisiones y habitaciones..."*
*DJE, 2/209 or. (1870)*



*43° 11' 16"* *2° 35' 50"* *Gerediaga Elkartea / Txelu Angoitia*

Neurri handiko baserri honen gaineko lehen dokumentu aztarna 1704ko Bizkaiko lehen suerroldan aurkitzen dugu *Ugarte*. XVIII. mendeko lehen erdialde horretan *Ugarte* eta *Vgarte* (1745, Bizkaiko su-erroldak) moduan agertzen zaigu dokumentatuta. Hortik aurrera, *Sarriugarte* (1825, PE/1825.) eta *Sarri-Ugárte* (1859, BUA, Nmcr.), *Sarri Ugarte* (1905) BUA, 40.) izango dira erabilienak. Ahozko transmisioan *Sarríugárte* eta batez ere *Uhárte* edo *Uhérte* izan dira formarik erabilienak.

Etxe handia, bizitza bikoa, auzoan dauden beste batzuen antzera eraikia, *Sarrionaindia* (**Ikus Sarrionanindia**), *Sarriurizar* (**Ikus Sarriurizar**) edo *Zereintza* (**Ikus Zereintza**) kasu. Ondo bereizten dira ohiko harrizko bi gorputzak aldamenetan, harlanduz inguratutako leihoekin beheko solairuan, hormetan ez bezala, hauetarako harlangaitza aukeratu baitzuten. Erdian, egurrezko dintela duen atartea dauka, harlanduzko janba eta harkantoiek eutsia. Lehengo solairuaren ezaugarria egurrezko egitura da, tarteko adreiluzko hormekin, eta leihoak ere halakoak dira. Ganbaran, berriz, egurrezko balkoia du alderik alde. Horma zaharragoak dituen arren, etxearen tankera XVII. mendean hedatu zena da, bat letorkeena 1709 datarekin, eskumako atean ageri den bezala. Baina badu berezitasun bat, desberdin egiten duena; gailurra ez dator bat atartearen erdiarekin. Baliteke handitze baten ondorioz gertatzea aldaketa hori, gorengoko balkoia ere beranduagokoa delako.

# Sarriurizar

etxebizitza

Aldaerak: Urizar
Ahozkoa: Uxar



*43° 11' 40"* *2° 35' 53"* *Gerediaga Elkartea / T. Angoitia*

*"... la casería titulada SarriUrizar...en el termino de la anteiglesia de Berriz en la barriada de Sarria,...consta de dos viviendas ocupa una planta de noventa y siete estados, equivalentes a trescientos setenta y nueve metros con inclusión del horno y escalera exterior, se compone en su piso llano de zaguan común para las dos viviendas, dos cocinas, dos aposentos, horno para las dos viviendas; en el piso altos, dos dormitorios y pajares, y sobre los dormitorios camarotes..."*
*DJE, 4/202 or. (1880)*

Baserri honen gaineko lehen arrasto dokumentala 1704ko Bizkaiko lehen su-erroldan aurkitzen dugu: *Urizar.* XVIII. mendean horrela agertuko da dokumentatuta batez ere, *Vrizar* (1745, Bizkaiko su-erroldak). XIX. mendetik aurrera, *Sarriurizar* (1825, PE/1825.), *Sarri-Urízar* (1859, BUA, Nmcr.), *Sarriurizar* (1880, DJE, 4/ 202. or.) eta *Sarri-Urizar* (1910, BUA, RU.) izango dira erabilienak. Ahozko transmisioan *Uxar* moduan ezagutzen da, auzotarren artean.

Bizitza bikoa izandako etxea dugu, gaur egun batekoa bada ere. Haren tankera auzoko beste batzuen estilokoa da, *Sarrionaindia* (**Ikus Sarrionaindia**) eta *Zereintza* (**Ikus Zereintza**) kasu, XVII. mendean asko zabaldu zena. Harrizko bi gorputz ditu, aldamenetan, eta erdian, material merkeagoekin egindako beste gorputz bat dauka. Lehenengoen artean, aparte bereiztekoa da ezkerrekoa, kontrakoa baino kalitate hobean jasoa, harlanduzko tailuek islatzen duten moduan. Gainera, kantalean mentsula bat egin zioten erdiko egurrezko dintelari eusteko, ez hala beste aldean, egurrezko zutoina baino ez baitzioten egin. Harlangaitza nagusi da hormetan, eta leiho-inguruetan, berriz, harlandua, erdiko gorputzean eta eskuma aldeko lehenengo solairuan ezik. Erdiko gorputzari dagokionez, harrizko oinaren eta zurezko zutiko baten gainean eraikitzen da, egurrezko egitura du eta tarteak harlangaitzaz eginda. Teilatupeko gorengo hirukia zabalik dauka, eta haren egurrezko armadura erakusten du.



# Ubillabarria (-a) etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Ubíllebárri



*43° 11' 32"* *2° 36' 8"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Bizitza bateko eraikin berria, 1990eko hamarkada hasieran eraikitakoa. *Ubilla* (**Ikus Ubilla**) baserriaren familiakoena izanik, bertan jaiotakoek *Ubillabarria* izena jartzea erabaki zuten. *Ubilla* eta *Ubillagoikoa* (**Ikus Ubillagoikoa**) baserrien goialdean kokatzen da, errepidearen beste aldean. Ahozko transmisioan *Ubíllebárri* forma erabiltzen dute.

Eginda dagoen parajeko aldatsa aprobetxatu zuten garajea egiteko, sarrera aldamenean eginik; baina fatxada nagusia da denetan erakargarriena. Guztiz simetrikoa da, eta inguruko baserrien ezaugarri batzuk hartu zituzten berau antolatzeko. Indarra ardatzean jarri zuten, alboetan bi pisuetan leiho bana besterik ez duelako. Erdian baoak nagusi dira, hots, dinteldun atartea eta gaineko balkoia, eta izkinan, berriz, teilatupean, imitazioko egurrezko egitura. Etxearen eta atartearen kantaletan harria erabili zuten, horma zuriarekin kontrastea eginaz.

toponimia

*Leku bat baino gehiagotan dugu izen hau Euskal Herrian eta ulergarria da egoera hori esangura ikusita. Toponimo honen osagaiak* ur *eta* bil *dira, hau da "erreken elkargunea". Izenaren bigarren zatiak aldiz, jatorrizko* Ubilla *(***Ikus Ubilla***) baserriaren inguruan eraikitako etxe berria dela adierazten du.*





# Ubilla

etxebizitza

Aldaerak: Ubillazpikoa
Ahozkoa: Ubílle



43° 11' 33" 2° 36' 14" Gerediaga Elkartea / T. Angoitia

*"... la casería rústica titulada de Ubilla azpicoa...radicante en la Cofradía o barriada de Sarria.... componiéndose la caseria de piso llano, con zaguan, cocina con dos cuartos, cuadras y leñera, y de piso principal con tres cuartos desban y pajar sobre la cuadra, y horno de cocer pan..." DJE, 1/83 or. (1863)*

Baserri honen gaineko lehen aipu dokumentala 1605. urtean aurkitzen dugu: *Ubilla* (1605, BAHP, A835/32.). Gerora, Bizkaiko su-erroldetan *Ubilla* (1704) eta *Ubilla Aspicoa* (1796) aurkitzen ditugu. Kontuan izanda baserri bi zeudela, *-azpikoa* eta *-ganekoa* erabiltzen dira biak bereizteko: *Ubilla azpicoa* (1826, BAHP, A297/15) eta *Ubillaganecoa* (1897, DJE, 7/ 11. or.). Beste dokumentu batzuetan, 1859ko izendegia kasu, *Ubillas* (1859, BUA) era dokumentatuta dugu. Mendeetan zehar aldaketa gutxi jasan duen izena da honako hau, eta lehen aipatutakoaz aparte, *b* edo *v* erabiltzea da aldaketa bakarra: *Ubilla* (1825, PE/1825) edo *Uvilla* (1905, BUA, 40). Auzotarren artean *Ubílle* da forma erabilia.

XVIII. mendeko baserria, sarrerako arkuko datak argi uzten duen moduan. Garaiko etxea da, bi solairuduna eta ganbaraduna. Bi isurkitako teilatua dauka, harlangaitzez eraiki zen, eta harlandua erabili zuten ohiko lekuetan, hau da, kantaletan, baoetan eta sarrerako arku ederrean. Horren giltzarrian honela jartzen du zizelkatuta: *"AÑO 1777"*.

toponimia

*Leku bat baino gehiagotan dugu izen hau Euskal Herrian eta ulergarria da egoera hori esangura ikusita. Toponimo honen osagaiak* ur *eta* bil *dira, hau da "erreken elkargunea".*



# Ubillaganekoa (-a) etxebizitza

Aldaerak: Ubillagoikoa
Ahozkoa: Ubíllegáne / Ubíllegane / Lanpárrena

*"... la casería nombrada Ubillaganecoa... en la cofradía de Sarria, en jurisdicción de la anteiglesia de Berriz... es de moderna construcción y se compone de planta baja, piso principal y segundo, ocupa de planta con inclusión de la franquicia setenta y siete estados equivalentes a doscientos noventa y siete metros cuarenta y siete decímetros cuadrados..."*
*DJE, 2/209 or. (1870)*



*43° 11' 33"* *2° 36' 13"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

Baserri honen gaineko lehen aipu dokumentala 1825. urteko polizia-erroldan aurkitzen dugu: *Ubillaganecoa*. *Ubilla* (**Ikus Ubilla**) baserriaren goialdean zegoen kokatuta jatorrian, eta sute baten ondoren, familiak beheko partean zuen lurretan eraiki zuen baserri berria, *Ubilla* baserriaren ondoan. Ondoan zuen baserritik bereizteko, *Ubillaganecua* (1866, DJE, 2/ 33. or.) eta *Ubillaganecoa* (1897, DJE, 7/ 11. or.) moduan agertzen da erregistratuta. Auzotarren artean, *Ubíllegáne*, *Ubíllegane* eta *Lanpárrena* formak erabiltzen dira.

XIX. mendeko etxea, 1870ean egin berria zena. Alboan, beste alde bat erantsi bazioten ere, etxearen hasierako taxua bistakoa da. Bi isurkitako teilatua eta goranzko joera du, hiru ardatzetan antolatuak izanik bao guztiak. Horrela, beheko solairuan, atea eta alde bakoitzean, leiho bana ditu. Gainekoan, hiru leiho ditu, behekoekin lerrokatuta, eta ganbaran, egurrezko balkoia. Harlangaitzez egin zuten, ohitura zen moduan, eta kantaletarako eta bao inguru guztiak egiteko utzi zuten harlandua.

toponimia

*Leku bat baino gehiagotan dugu izen hau Euskal Herrian eta ulergarria da egoera hori esangura ikusita. Toponimo honen osagaiak* ur *eta* bil *dira, hau da erreken elkargunea. Izenaren bigarren zatiari dagokionez,* ganekoa*, jatorrizko* Ubilla *(***Ikus Ubilla***) baserriaren goiko aldean kokatuta zegoela adierazten du.*




# Ugartebidea (-a)

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa:



*Berriz Iruditan*

Desagertuta dagoen baserri honen gaineko aipuak Bizkaiko su-erroldan ageri dira XVIII. mende hasieran: *Ugarte Uidea* (1704). Beste hainbat baserri izenekin gertatu izan den moduan, honek ere aldaera gutxi ezagutu ditu mendeetan zehar, XIX. mendeko aipamen bi izan ezik. *Ugartebidéas* (1859, BUA, Nmcr) eta *Ugartebidea* (1867, JCR 2908/008) beste guztietan v letraz idatzirik agertzen da, *Ugartevidea* (1825, PE/1825) eta *Ugartevidea* (1910, BUA, RU) izanik horren adibide. 1967ko Udal-erroldan *Ugartebide* aurkitzen dugu. Dena den, aipatutako 1859ko izendegian *Ugartebidéas* agertzen da, horrek esan gura du urte horretarako *Ugartebidetxebarria* (**Ikus Ugartebidetxebarria**) baserria eraikita egongo zela. Berriztarren artean, *Eltxuena* moduan ere ezagutu da, eta ahozko formarik erabilienak, hain zuzen ere, *Uhertebíde* eta *Eltxúena* dira.

Jausita dagoen etxea da, sasoi desberdinetako atalekin. Hala ere, oraindik antzeman daitezke bere ezaugarriak. Beheko solairua harlanduzkoa zuen eta aldamenean atartea zeukan, zurezko dintelduna. Lehengo solairua eta ganbarakoa, berriz, egurrezko egituraz armatua, leihoak bezala. Teilatua bi isuritakoa zuen. Leihoburu bateko inskripzioak egin zeneko data eta egilearen izena argituko dizkigu. Gurutzearen babesean dio:"ESTA CASA IÇO JUAN DE SSOLA ALDE / LOINBE AÑO DE 1702".

## toponimia

Ugarte *hitz arrunta da eta ibaietan dauden irlak izendatzeaz gain bi erreken arteko gunea ere izan daiteke. Hitz honen osagaiak* ur *eta* arte *dira. Toponimo honetan* Ugarte *leku izenaz gain* bide *eta artikulua ditugu. Euskal toponimia jatorrean bide bat nora zihoan adierazteko oso arrunta izan da* izen+bide *egitura eta urriagoa izan da* izen+ko+bide *egitura. Hala ere, Nafarroa eta Arabako eskualde zabal batean antzina* izen+ra+bide *egitura erabiltzen zen:* Miñaugutxirabidea *toponimoan ikus daitekeen bezala.*



# Ugartebidetxebarria (-a) etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Uhertebíde etxebarría



43° 11' 12" 2° 36' 1" Gerediaga Elkartea / T. Angoitia

Arestian aipatu dugun moduan, 1859ko izendegian *Ugartebidéas* (1859, BUA, Nmcr) agertzen da, horrek esan gura du urte horretarako *Ugartebidetxebarria* baserria eraikita zegoela. Dena den, dokumentazioan XX. mendean topatuko ditugu lehendabiziko aipuak: *Ugarte Echebarria* (1905, BUA, 40) hasiera batean, eta *Ugartevide Echebarria* (1910, BUA, RU) eta *Ugartebide echevarri* (1967, BUA, CE) geroago. Auzotarren artean, *Uhertebíde etxebarría* da ahozko formarik erabiliena.

Izenak adierazten duen moduan, etxe berria da, XIX. mendean egindakoa, eta garaiko beste etxe batzuen ezaugarriak ditu. Bi isurkitako teilatuaren azpian, harlanduz inguratutako leihoak eta dinteldun atea dauzka, hiru ardatzetan antolatuta. Bertikaltasuna markatzen dute ateak, erdian, eta gaineko bi leiho luzeek. Alboetan, leiho bana dauka, txikienak hirugarren solairukoak izanik, teilatuaren okertasunera egokitzeko. Goranzko joera hausteko, ganbaran, alderik alde doan egurrezko balkoia egin zioten. Hormak harlangaitzezkoak ditu. Sarrerako ateburuko inskripzioaren bidez, egilearen eta dataren berri daukagu: *"A ESPENSAS DE JOSE/ DE ORVE AÑO 1840"*.

toponimia

Ugarte *hitz arrunta da eta ibaietan dauden irlak izendatzeaz gain bi erreken arteko gunea ere izan daiteke. Hitz honen osagaiak* ur *eta* arte *dira. Toponimo honetan Ugarte leku izenaz gain bide eta artikulua ditugu. Euskal toponimia jatorrean bide bat nora zihoan adierazteko oso arrunta izan da* izen+bide *egitura eta urriagoa izan da* izen+ko+bide *egitura. Hala ere, Nafarroa eta Arabako eskualde zabal batean antzina* izen+ra+bide *egitura erabiltzen zen:* Miñaugutxirabidea *toponimoan ikus daitekeen bezala. Izenaren bigarren zatiak* Ugartebidea *(***Ikus Ugartebidea***) baserriaren inguruan eraikitako etxe berria zela adierazten du. Berez, egun erorita eta sasi artean dagoen* Ugartebidea *baserritik berrehun bat metrora kokatzen da baserri hau.*

# Ugarteburu etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa:



*43° 11' 22"* *2° 35' 50"* *Berriz Irudítan / J.A. Ramos*

Sarria auzoaren goialdean XX. mendeko azken laurdenean eginiko bizitza bateko eraikina. Etxe berri hau *Sarriamatza* (**Ikus Sarriamatza**) baserriaren *"Asue"* lur-sailean eginda dago. Jatorrizko eraikinak 2004. urtean erreforma txiki bat jasan zuen, aurrealdean aterpea gehitu zitzaionean.

Sasoiko txaleten estiloan jaso zuten, euskal tankerara hurbiltzeko asmotan. Teilatua bi isurkitakoa du, txapitulekin, eta beheko solairuaren gainean, teilatupeko beste solairu bat atera zuten. Fatxada nagusiaren indarra ardatzean dago: atartea, kanpora irtendako aterpearen babesean, eta horren gaineko balkoia. Horien alde banatan, leihoa eta balkoi txikia ditu, eta atzeratuago, beste leiho bat beheko solairuan. Zokaloa forratzeko, harria erabili zuten, eta teilatupean, aldiz, egurra, imitazioko egitura egiteko.

## toponimia

Ugarte *hitz arrunta da eta ibaietan dauden irlak izendatzeaz gain bi erreken arteko gunea ere izan daiteke. Hitz honen osagaiak* ur *eta* arte *dira. Izenaren bigarren zatiak kokapenarekin bat dator, etxea eraiki zenean kontuan izan zen kokapena edo toponimia eraikin berriari izena emateko, eta kasu honetan* Sarriugarte *(***Ikus Sarriugarte***) baserriaren goikoaldean dagoen etxea dugu, hortik izena.*



# Ugarterrota

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa: Errótie / Ugérterrota

*"... la casa molino titulada Sarriugarte... situada en jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz, que comprende con inclusión de la tejabana, zaguan y huerta, trescientos cuarenta y nueve estados, equivalentes a trece areas y veinte y ocho centiareas decabida, y la que se compone de piso bajo y alto, y de tres moliendas, con sus correspondientes pisos, divisiones y habitaciones..."*
*DJE, 2/215 or. (1870)*



*43°11'1"* *2°35'56"* *Berriz Iruditan / J.A. Ramos*

*Arrierreka* ur-emariak aprobetxatzen zituen errotetako bat dugu honako hau, Sarria kofradiaren beheko aldean kokatzen dena, bertako eskolen parean. Baliteke *Sarriugarte* (**Ikus Sarriugarte**) baserriarekin lotura izatea, eta baliteke, horren ondorioz, dokumentazioan gehiegi ez agertzea. 1859ko izendegian agertuko da lehenengoz, *Ugarteco-errotéa* (1859, BUA, Nmcr) moduan, eta XX. mendean errota honi egindako aipamenak ugariagoak izango dira: *Ugarteco Errota* (1905, BUA, 40) eta *Molino de Ugarte* (1910, BUA, RU) mende hasieran, eta euskarazko izendapena 1967ko eraikin-erroldan, hots, *Ugarterrota.* Auzotarren artean, *Errótie* eta *Ugérterrota* dira ahozko formarik erabilienak.

Eraikin desberdinen arteko multzoan, etxea zurituta dagoelako gailentzen da. Errotaren ondoan kokatzen da, puntu-erdiko arkua duen ubidean, XVIII. mendean egiten zirenen modukoa. Etxeak solairu bi eta teilatupea ditu, bi isurkitako estalkiaren azpian. Obra xumea izan zen, horrelako eraikinetan gertatzen zen moduan, guztiz harlangaitzaz egina. Gainera, asimetrikoa da, teilatuaren ardatza kontuan hartzen badugu. Baoak leiho-erakoak dira, solairu bakoitzeko bi balkoiak izan ezik. Hala, lehenengo pisukoa alde batean dago, sarrerako atartearen gainean; baina bigarrena dugu interesgarriena. Teilatuaren ardatza eta habea ere bistan dauzka, eta hegal zabalari eusteko bi besoen artean kokatuta dago.

toponimia

*Ugarte hitz arrunta da eta ibaietan dauden irlak izendatzeaz gain bi erreken arteko gunea ere izan daiteke. Hitz honen osagaiak ur eta arte dira. Kasu honetan izenaren bigarren zatiak baserriaren funtzionaltasunarekin lotuta dago. Seguruenik Ugarte edo Sarriugarte baserriaren errota izango zen honako hau, hortik hartzen duen izena.*

# Zereintza

etxebizitza

Aldaerak: Zaintza
Ahozkoa: Sáintze / Séintze



43° 11' 36" 2° 36' 11" Berriz Iruditan / J.A. Ramos

*"... la casería rústica titulada Cereinza... radicante en jurisdicción de la Anteiglesia de Berriz que ocupa un area de doscientos setenta y dos estados, y se compone de una habitación y un piso..."*
*DJE, 1/23 or. (1873)*

*Patala* (**Ikus Patala**) inguruan kokatzen den bizitza bakarreko baserri honen lehen aipuak Bizkaiko su-erroldetan aurkitzen ditugu, *Cereniza* (1704), alegia. Gerora, dokumentu guztietan aldaera desberdinak agertzen ditu, eta bai *S* bai *C* hizkiez idatzita agertzen da: *Sereinza* (1825, PE/1825) eta *Sereinza* (1857, BUA, Viv) hasiera batean, eta gero, *Cereinza* (1865, DJE, 1/ 185. or.). XX. mendean eta ahozko formen eraginez, *Ceince* (1905, BUA, 40) eta *Ceimtza* (1967, BUA, CE) formak topatzen ditugu. Auzotarren artean, ahozko transmisioan, ganaduarengatik eta gaztarengatik famatua izan den baserri hau *Sáintze* eta *Séintze* moduan ezagutzen da.

Bizitza bakarreko etxea dugu, auzoan dauden beste batzuen antzera eraikia eta XVII. mendean hedatu zen taxuan, *Sarrionaindia* (**Ikus Sarrionaindia**) eta *Sarriugarte* (**Ikus Sarriugarte**) kasu. Ondo bereizten dira ohiko harrizko bi gorputzak aldamenetan, harlanduz inguratutako leihoarekin beheko solairuan; hormetan ez bezala, horietarako harlangaitza aukeratu baitzuten, kalitate onekoa bada ere. Erdian, egurrezko dintela duen atarte bat dauka, harlanduzko janbek eta harrizko kantoiek eutsia eta harrizko oinarekin eta egurrezko zutikoarekin. Gaineko balkoi bakar batek batzen ditu bi leiho luzeak. Ganbaran, beste bao txiki bi ditu. Isurki biko teilatua dauka, hegal zabalekoa, eta beste baserri askotan legez, besoak ditu eusteko.

## toponimia

*Izen honen esangura iluna bada ere bilakaera oso ederra euskal onomastikaren eredua delako. Testigantza zaharrenean* Zeneriza *(*Zerenitza *irakurri behar dugu) moduan ageri da, baina 1745etik aurrera* Zereintza *da. Kontua da, behin baino gehiagotan esan dugun bezala, euskaraz antzina* -n *mota bi zeudela, gogorra eta leuna eta azken hori desagertu egin zen (*Galdakao, Zestoa...*). Baina desagertu arren zenbait kasutan bere hondarra gelditu da.* Abadianotik Abadio *sortu zen eta gero* Abadiño. *Billaro hiria* Arenatza *izeneko lekuan sortu zen, eta leku horri gaur egun* Areantza *esaten diote, Kasu honetan ere desagertu zen* -n *hori berragertu zen baina lekuz aldatuta* Zeneritza > Zereintza.



# Zumardia

etxebizitza

Aldaerak:
Ahozkoa:



43° 10' 53" 2° 36' 19" Berriz Irudita n / J.A. Ramos

Abadiñoko Gerediaga auzotik Garairantz doan bidearen ondoan kokatzen den bizitza bateko txaleta. 1995. urtean eraikitako etxe honek *Zumardia* izena hartu du.

Txalet berria dugu, inguruko baserri-etxeen tradizioari begiratuta jasotakoa. Fatxada era simetrikoan antolatua dauka, isurki biko teilatupean. Harria erabili zuten beheko solairuan, eta horma luzituak, bestean. Gehienetan legez, erdialdea dauka indartuta, hor baititu kokatuta atartea, egurrezko dintelduna, eta gaineko balkoi sakona. Aldamenetan leiho bana dauka, beheko solairuan, eta balkoia osatzen duen leiho luzea, aldiz, gainekoan. Horko leihoburuak egurrezkoak dira, baita teilatuko habeak eta hegalari eusten dioten besoak eta izkinan dagoen imitaziozko egitura ere, aldameneko bi aterpeetan errepikatuko dena.

toponimia

*Etxe izen honen osagaiak* zumar *zuhaitz izena,* Ulmus sp, *ugaritasuna adierazten duen* -di *atzizkia eta artikulua dira eta iraganeko basoen oihartzuna dakarkigu gogora. Zumarra ohikoa zen, basoak osatzen ez bazituen ere, baina XX. mendean Ameriketatik etorritako gaixotasun batek ia desagertarazi du Europatik. Gaixotasun hori zomorroek zabaltzen dute eta hilabete baten buruan hil dezake zumarrik sendoena. Europako hainbat lekutan belardien arteko hesietako zuhaitz guztiak hil ditu. Antzina gurdietan eta itsasontzietan erabiltzen zen bere zura.*

*Arestian aipatu dugun moduan, Berrizko toponimia ikerketarekin hasi ginenean herriko leku-izenei buruzko informazio eta dokumentazio ugari biltzea zen helburu. Datu-bilketa egin ostean, toponimo horiek gizarteratu nahi izan ditugu eta fase horretan txertatu behar dugu liburu hau. Lan honek, baserriez gain Berrizko leku izenak bildu ditu. Segidan 2013an argitaratutako* Berrizko toponimoen mapan *jasotako leku izen batzuk aipatuko ditugu.*

## ***Urak…***



*Berriz Irudítan / T. Angoitia*

*Lehenik eta behin baserri edo eremu konkretu batekin erlazionatutako leku-izenak aipatuko ditugu. Horien artean erreken izenak ageri dira. Gehienetan inguruko etxe baten izena hartzen badute ere, orokorrean herritarrek ez dute izenik aipatzen, beti erreka erreferentzia hartzen da baina izen berezirik gabe. Honek adierazten du toponimoak azken finean jabetza erakusten duela eta errekek ez dutenez jaberik, ez zaie arreta berezirik jartzen.*

*Horren adibide dira Arminerreka (Andikoa), Agirrerreka (Sallobente-Mendibil), Ametzuerreka (Eitua), Aiagaerreka (Andikoa) Loitzaterreka (Murgoitio) eta Uriberreka (Murgoitio), Lasuenerreka (Sallobente-Mendibil) eta Olaberreka (Sallobente-Mendibil), Iturritxueta erreka (Sallobente-Mendibil) eta Berrizko historian energia arloan hain garrantzitsua izan den Arrierreka (Sarria - Eitua).*

“…El arroyo Arrierreka, que baja del monte Oiz, forma un paisaje que puede considerarse como un gran museo al aire libre que incorpora toda una serie de elementos que explican en buena parte la historia de Berriz y sus alrededores. Aún hoy, se percibe la herencia acumulada de la actuación humana, en forma de presas, balsas, cauces, máquinas, caminos, puentes de piedra, restos de muros, etc; una variada serie de instalaciones mecánicas, bienes inmuebles e infraestructuras hidráulicas con gran valor etnográfico, histórico, simbólico y paisajístico…” (Ibáñez, 2011: 44)

*Kasu gehienetan ubidearen inguruan, goialdean dagoen baserri baten izena hartu dute. Batzuetan ur bide hauek kofradien arteko mugak markatu edo definitu dituzte. Aipagarria da, batzuetan, erreka berberak izen desberdinak dituela bere ubidearen zati desberdinetan. Horrela, Murgoitioko Zubierrementaria baserriaren inguruetatik pasatzen den ubidea Loitzaterreka moduan ezagutzen badute, Loitzate baserrian aldiz, Uriberreka moduan ezagutzen da. Eta gauza bera dugu Sallobente-Mendibil / Okango aldean. Olabe inguruan goitik datorren ubidea Lasuenerreka moduan ezagutzen bada ere, Lasuen etxeen inguruan aldiz, Olaberreka moduan ezagutzen da, Olaberantz goitik behera doazen urak, alegia.*

*Horiekin batera beste erreka hauek aurkitzen ditugu Oiz eta Arietzuko magaletatik behera: Albaierreka (Andikoa), Altzerreka (Murgoitio), Arlabanerreka (Sarria), Garratzerreka (Murgoitio), Karkamo erreka (Andikoa-Sarria), Urzabal (Murgoitio – Eitua-Okango) eta Urzuloerreka (Sarria)*

*Eta Berrizko toponimian, erreka edo urekin lotutako beste leku izen batzuk ere ageri dira: Errekagane (Okango), Errekaondoko soloa (Sarria) eta Urbitarte (Eituan eta Sallobente-Mendibilen) besteak beste. Eta ez dugu ahaztu behar, errota inguruetan aurkitzen dugun andapara izena. Andapara hitza asko erabili zen garai batean baina erroten gorabeherekin, gaur egun jendeak ez daki bere esanahia. Horrela deitzen zaio errotek duten ur-biltegiari, errotarriak mugitzen duen gurpilari, ura gordetzeko indarra ematen dio. Eituan dugu Andaparagana toponimoa, kasu honetan andapara horren goialdean kokatzen den soroa izendatzeko. Eta ura eta errota / ola kontuekin gaudenez, ezin ditugu ahaztu eraikin hauen inguruan aurkitzen ziren presak. Hori dela eta Presaburua (Murgoitio), Presaondo (Murgoitio) eta Presalde (Sallobente-Mendibil) moduko leku izenak sortu ziren.*

*Urarekin jarraituz, Berrizen kokatzen diren iturriak aipatuko ditugu orain. Besoitaiturria baserrian, (Ikus Besoitaiturria) etxeko horman dagoen txorroa ireki besterik egiten ez duenak ezin du imajinatu zer nolako lana zen ura etxera eroatea, bereziki hotz edo euria egiten zuenean. Murgoition, “adibidez”, Metaliturri dugu Loitzate baserriaren inguruan. Gaztelaniaz “fuente de hierro” deitzen zaien iturriei Bizkaian metaliturri esaten zaie burdinaren zaporea dutelako. Aipatutako iturriaren ondoan Loitzatekoiturriondoa izeneko soroa aurkitzen dugu. Okangon Bekoiturri dugu, izenari erreparatuta, agian goikoiturria ere egongo zen garai batean. Sallobente-Mendibilen, Okaiturri eta Olaiturri ditugu, baita Iturriondo izeneko soroa ere. Gainera toponimia lanari esker, Abaitua etxe multzoan, iturri ondoan eraiki berri den etxe batek Abaituiturriondo (Ikus Abaituiturriondo) izena hartu du.*

*Eituan Tellaiturria eta Ametzuiturria aurkitzen ditugu. Amaitzeko Sarrian Kakiturri, Iturboitiko iturria eta Txopeniturri aurkitzen dira.*

### *... soroak...*

*Errekekin ikusi dugun moduan, gauza bera aurkitzen dugu soro, landa zein tontorren izenekin. Askotan, inguruan aurkitzen den baserriaren erreferentzia hartu izan du leku izenak: Agirregoitiburu (Andikoa), Andikoazpi (Andikoa), Aretxagaburu (Sallobente-Mendibil), Bekoerrotaburu (Murgoitio), Besoitagain (Sallobente-Mendibil), Berrizburu (Eitua), Bidebarrieta (Sallobente-Mendibil), Bizkargain (Sallobente-Mendibil), Deskargalde, Deskargabaso edota Deskargazpiak soroak (Sallobente-Mendibil), Iturritxueta (Okango), Kotxeraburu (Sallobente-Mendibil), Larizgain (Okango), Legorretaldebideburua (Sallobente-Mendibil), Lupitagana (Sallobente-Mendibil), Okaldie (Sallobente-Mendibil), Otsaitaburu edo Otsaitalde (Eitua), Sanjuanpea (Murgoitio) edota Santrokaz (Sallobente-Mendibil), nahiz eta azken kasu honetan Santrokaz baserria Mallabiakoa izan. Kotxeraburu leku izena, Goiko kotxerarekin erlazionatuta dago, egun Txirriena moduan ezagutzen den baserriarekin alegia. Palazioak, berriz, kotxera bi zituen, beheko kotxera (Ikus Kotxera) palazioaren lorategi sarreran, Ategorridxe, eta aipaturiko goiko kotxera edo Txirrinea.*

*Beste kasu batzuetan, baserri jabearen goitizenak bere lekua izan du bertako toponimian, hala gertatu da Dukiena (Eitua) toponimoarekin. Arginzonisbeaskoaldekoa (Ikus Arginzonisbeaskoaldekoa) baserriaren eraikin akzesorioa zena, ezizen honekin ezagutzen zen, inguruan famatua izan den Kondiena ezizenekin batera (Ikus Bilbatuazpikoa). Antza, baserri honetako ugazaba Ereñagako tabernara egunero joaten zen. Berriztarren artean Arginzonisbeaskoaldekoa baserria esaten da, baina gaur egun bertan dagoen Zalditegiak hartu du izen hau.*

*Eraikin berriak izendatzerakoan, toponimia kontuan izatea txalogarria da, gure ondarea babesten baitu. Gogoan izan behar dugu Nazio Batuen erakundeak ONDARE izendatu dituela toponimoak eta guztion betebeharra dela hauek zaintzea. Hortaz, eliza erromanikoa babesten dugun bezala babestu behar dugu gure ondare toponimikoa. Beraz, Toki Polita, Villa Encarnita eta horrelako izenak erabat errefusagarriak dira. Berrizen XX. mende amaieran egindako hainbat eraikinek jarrera hau erakutsi dute, tartean Aingeruena, Sagasti, Solozar, Ugarteburu, Errekatxu, Errotetabarria, Errekaondo, Intxurtze, Pastoriena, Abaituburu, Pozaena, Abaituiturriondo, Bolunzarburu, Bolunbarriburu, Ubillabarria, Bidekurutzeta, Mugaburu, Zumardia, Aiaga, Aiagalde, Aiagape, Aiagaurre, Lebarietabarria, Lebarietalde, Larrinburu, Iturbeburu eta Iturbegana. Adibidez, Olaben aurkitzen den Intxaurtxuaga tontorraren ahozko erabilera aukeratu da bertan egindako azken txaleta izendatzeko, Intxurtxu (Ikus Intxurtxu).*

## *... basoak...*

*Berriz elizatearen mapa toponimikoa ikuskatzerakoan, kolore berdea nabarmentzen da lehen begirada batean. Betzuen eta Oizko etxeak ezikAndikoa eta Sarria etxe multzoetatik gora, basoa da dena. Hortaz. baso izenek ere bere garrantzia izan dute Berrizko historian eta batez ere lehengo jarduera ekonomikoan. Jabego pribatua duten basoak herri edo kofradietako basoekin nahasten dira. Hauen artean Abadiñobaso (Sarria) toponimo bitxia dugu, bertan Abadiño herri izena dugularik. Garai batean, Euskal Herrian ohikoa zen herriek baso jabetzak izatea eta hau da horren testigantza: Abadiñoren basoa. Eta hau da herriaren euskal izenaren lekukotza jaso duen bakanetako bat, bakarra ez bada. Honekin batera kofradietako basoak ere baditugu; Amabirjiñabaso (Sarria), hau da, Andikoako Ama Birjiñaren basoa, eta Okangobaso (Sarria) Okango kofradiako basoa.*

*Baso hitz osagaiarekin jarraituz nabarmendu behar da Alemaniako Schwarzwald toponimo ezagunaren euskal bertsioa Eituan dugula: Basobaltza. Antzina, Berriz eta Euskal Herri osoa, basoz estalita zegoen. Beraz, baso bati izen hau jartzeko, benetan beldurgarria izan behar zuen.*

*Kaparrak, kaletarrak uste baino ugariagoak dira gure basoetan, bereziki behorrak eta behiak solte bizi diren guneetan eta hozka egiten dute, nahiz eta txakurren kaparrak eta pertsonenak desberdinak izan, hortaz ez da arraroa Berrizen Kaparrabaso (Murgoitio) toponimoa topatzea.*

*Beste hauek ere ahaztu barik: Amamabaso (Murgoitio), Basobizkar (Murgoitio), Basosoro (Sallobente-Mendibil), Demandabaso (Murgoitio), Olaiturribaso (Sallobente-Mendibil), Sartenbaso (Andikoa), Txastabaso (Sarria) edo Txopobaso (Sarria). Amamabasoren kasuan, ahoz esaten da amama hitzak, batzuetan, ugaritasuna adierazten duela eta, ondorioz, 'baso aberatsa dela'.*

## *...tontorrak...*

*Oizko tontorraz gain, herriak beste mendi eta tontor aipagarriak baditu: Murgoitio aldean aipatzekoak dira Abadiño kontran dauden Martilar, Anbotobitxi eta Garagorbe. Martilar Berrizko Murgoitio eta Abadiñoko Gaztelu auzoak banatzen duen mendi magalean aurkitzen dugun punturik altuenetariko bat da. Jasotako informazioaren arabera, antza, Gerra Zibilaren garaian garrantzia handiko zonaldea zen honako hau. Murgoitioko auzokoek Zalduerrekatik gora dagoen mendia izen berberarekin ezagutzen dute, nahiz eta Martilar konkretuki Gomendiourrutia baserriaren goialdean kokatu. Gaur egun linea elektrikoaren poste bat dago bertan. Martilarreko goiko parte hori " gasaren linea" bezala ezagutzen da, bertatik gasa pasatzen baita.*

*Okango aldera, Zaldibar parean Garrazburu (Murgoitio) tontortxoa aurkitzen dugu, bertatik jaisten diren urek toponimo berbera izanik.*

*Sallobente-Mendibilen, aldiz, honako hauek nabarmendu behar dira: Torosto, Arietzu, Arietzubarrena eta Ganbarru.*

*Sarrian Ametzorbe, Egiluze, Itxasi, Jandolamendi, Kartafaltsueta, Otola, Tapiabe, Txara, Zazpiatxeta. Aipatutako Jandolamendi Jandola (irakur bedi Yándola) oso toponimo arrunta da mendebaldean. Horrela deitzen da, esaterako, Okondoko auzo bat. Izenaren bigarren osagaia argia da ola 'kortabasoa' baina lehenengoa ilunagoa dugu. Agian, pertsona izen bat dugu, Jaunti akaso?, Yandiola aldaera ere badugulako.*

*Eta beste hauek ere ezagunak dira Berrizen, Legaño (Okango), Olasamendi (Sallobente-Mendibil), Purpix (Andikoa), Sarrimendi (Andikoa - Sarria) eta Tanborra (Andikoa).*

## *... era guztietako izenak...*

*Esparru moduko soroak aurkitzen ditugu Sallobente-Mendibilen, Murgoition eta Okangon. Eta esparru izenarekin lotuta dauden beste hauek ere: Esparrugoikoa (Sallobente-Mendibil), Esparrusakona (Sallobente-Mendibil) eta Bekoesparrua (Murgoitio)*

*Bizkaiko toponimian gaztelu hitza be sarri ageri da, Erdi Aroko edo lehenagoko herrixka eta gotorleku eremuak izendatzeko. Berrizen era honetako leku izen bi aurkitzen ditugu; Gaztelugan eta Gazteluzar, Sallobente-Mendibilen.*

*Kamiñuaren harira sortutako leku izenak ere arruntak dira Euskal Herriko toponimian. Hala Kaltzadapie, Kamiñoburu edo Kamiñogane izeneko soroak Sallobente-Mendibilen. Gaur egun kamino edo kamiño hitza arauz kanpo egon arren, guk asko erabili dugu errepidea adierazteko, eta ez bakarrik Bizkaian, Nafarroan ere arrunta izan da toponimian.*



*Berriz Irudítan*

*Errebueltapea, Petrilgana edota Petrilpea soroak eta Atajue basobidea aurkitzen dira Sallobente-Mendibilen ere. Azken hau Lariz ingurutik Lasuen etxe inguruetara joateko erabilitako bideari jarritako izena da.*

*1877an, trenarekin batera, leku-izen berriak agertu ziren Berrizen, hala nola geltokiari Berriz-Olakueta jarri zitzaion, eta Trenbideondo leku izena agertzen da Eituan.*

*Amaitzeko, Bideganía (Andikoa) eta Bidepie (Sallobente-Mendibil) moduko izenak be azaltzen dira.*

*Gauza bera gertatzen da gurutzeekin. Kurutzeminaga, Kurutzepea eta Kurutzondo izeneko soroak aurkitzen dira Sallobente-Mendibilen, Lasuen etxe inguruan.*

*Berriz bezalako herri aldapatsu batean mendi izenez osaturiko leku izenak ugariak dira: Mendiburu eta Menditxo (Sallobente-Mendibil) eta Mendioste (Andikoa - Sarria). Eta gauza bera gertatzen da solo izenarekin; Solaburu, Solobarrena, Sololuzea eta Solotxikia bezalako leku izenak arruntak dira Berrizko kofradietan barrena.*

## ... eta bereziak direnak

*Dantzaleku (soroa / Okango). Oso toponimo arrunta da, dantzalekua herri askotan egoten baitzen. Sarritan bidegurutzetatik hurbil dauden leku lauak erabiltzen ziren erromeria osteko geldiune bezala. Gaur egun horrelakorik ez dago, autoz joaten garelako.*

*Aititesolo (soroa / Okango), Santisolo (soroa / Okango) eta Perusolo (soroa / Andikoa). Gaztelaniazko Pedro izenaren euskal kide arrunta Peru izan da, nahiz eta santua izendatzeko beste aldaerak erabili (Petri, Betiri...), baina XIX. mendearen amaieran Sabino Aranak asmatu zuen Kepa izenak baztertu zuen, erabat desagerrarazi ez bazuen ere. Oso ezaguna de Jesus eta Simon Pedroren arteko pasartea, Eliza harriaren gainean jasoko zuenekoa. Biak arameo hizkuntzan mintzatzen ziren, ez hebraieraz, eta hizkuntza horretan Simoni Kephas deitu zion, hau da, harria. Pasarte hori latinera itzuli zutenean, Simon Petrus moduan itzuli zen eta hortik sortuak dira Pedro, Peter, Peru... Sabino Aranak, berriz, jatorrizko Kephas-tik asmatu zuen Kepa.*

*Alanbreondue (Okango). Izen kuriosoa dugu honako hau, Arangurenazpikoa baserriaren soroa. Baserriaren aurrean dagoen sakonunea libratzeko, parean dagoen belarditik belar-fardoak garraiatzeko sistema sortu zen, alanbrea moduan ezagutzen zena. Hortik, alanbre horren ondoko soro izena. Gipuzkoako Ataun herrian XX. mende hasieratik antzerako sistema erabili izan da, belardietatik belar-fardoak baserrietara garraiatzeko, hura kablea moduan ezagutzen da. (Altuna, 1999).*

*Amaitzeko, ermita izenak aipatu behar ditugu. Dagoeneko desagertu direnak ere aipatu behar ditugu: San Gregorio, San Martin eta San Pedro, hirurak ermitaz josita dagoen Sallobente-Mendibilen kofradian. Azken hau San Pedro apostuluaren ermita da eta honen berri XVII eta XVIII. mendeetako*




*Erroteta aldea 1772an (Valladolideko Errege Txanzileriko Artxibategia, ARCV, Planos y Dibujos, Desglosados, 676, 1772).*

*udal eta eliza agerietan azaltzen da. Hala ere, berreskuratutako ondare arkitektonikoak erakusten duenez, kanposantu erabilera izan zuen 1890ean gaur egungo kanposantua inauguratu arte. Bertan egindako azken indusketa arkeologikoek (2010-2013) informazio historikoa definitu digute eta paraje horretan, Erdi Aroan ere kanposantu erabilera egin zela ziurtatu digute eta horrelakorik ez genekien, gaurdaino.*

# laburdurak

BUA / *Berrizko Udal Artxiboa*
DJE / *Durangoko Jabego Erregistroa*
BAHP / *Bizkaiko Artxibo Historiko Probintziala*
ARCV / Valladolideko Errege Txanzileriko Artxibategia

CE / *Censo de Edificios (Eraikin errolda)*
RU / *Rústica y Urbana (Landa-hiri)*
PE / *Polizia Errolda*
Viv / *Viviendas (etxebizitzak)*
Nmcr / *Nomenclator (izendegia)*

FAA / *Fernando Arana Agirresakona*
JOU / *Juan Onagoitia Uribezubia*

ALTUNA, Lourdes, (1999), Kablea Ataunen, Ataun, Ataungo Udala.

APEZETXEA ZUBIRI, Pello eta SALABERRI, Patxi (2009), Etxalarko etxeen izenak, Etxalar, Etxalarko Udala.

ARREGI AZPEITIA, Gurutzi (1999), *Origen y significado de las ermitas de Bizkaia,* Bilbo, Labayru Ikastegia.

ARRIEN BERROJAECHEVARRIA, Gregorio (1987), *Educación y escuelas de barriada de Bizkaia: escuela y autonomía 1898-1936,* Bilbo, Bizkaiko Foru Aldundia.

ASTARLOA, Pablo Pedro de (1803), *Apología de la lengua bascongada o Ensayo crítico filosófico de su perfección y antigüedad sobre todas las que se conocen en respuesta de los reparos propuestos en el Diccionario geográfico histórico de España, t. 2º palabra Nabarra,* Madrid, Geronimo Ortega.

AZKUE IBARBIA, Imanol (2008), *Zumaia, izena eta izana,* Zumaia, Zumaiako Udala.

BAESCHLIN, Alfredo. (1980), *La arquitectura del caserío vasco,* Bilbo, Biblioteca Vascongada Villar.

BARRIO, Jose Antonio et alii (1989), *Bizkaia. Arqueología, urbanismo y arquitectura histórica: I-Duranguesado y Arratia-Nervión,* Bilbo, Deustuko Unibertsitatea.

BIDART, Asier eta ERIZ, Miriam, (2006) *Elorrioko toponimia,* Elorrio, Elorrioko Udala : Labayru Ikastegia.

ERRASTI, Alberto (1994), *Iurreta Elizateko euskara eta toponimia,* Iurreta, Iurretako Udala.

ERRASTI, Alberto (2011), Zaldutik Zaldibarrera toponimia barrena, Onomasticon Vasconiae, 24. zk, Bilbo, Euskaltzaindia.

ETXANIZ IRAOLA, Ainitze eta ZALDUA ORTIZ DE GUZMAN, Irati (2010) Ordiziako leku-izenak, Ordizia, Ordiziako Udala.

ETXEGARAI, J.M. (1980), *La Actualidad de la Casa Blasonada en el País Vasco – Merindad de Durango,* Bilbo, Laiz.

GALÉ, Patxi (2000), *Bizkaiko Gailurren Katalogoa,* Bilbo, Bizkaiko Foru Aldundia. Kultura Saila.

GALÉ, Patxi (2010), *Atlas de Duranguesado-Arratia,* Bilbo, Nondik.

GERENABARRENA, Maite eta KAMIRUAGA, Akaitze, (2008), *Antxinako Berriz, bizimodua eta ohiturak,* Bilbao, Berrizko Udala : Labayru Ikastegia : Bilbao Bizkai Kutxa.

GORROTXATEGI, Mikel eta SALABERRI, Patxi (2000), *"Toponimia txikia arautzeko irizpideak", Euskera XLV,* Bilbo, Euskaltzaindia.

HAINBAT EGILE (2011), *Abadiñoko toponimia: ahozko iturburuak, iturri dokumentalak eta bibliografikoak,* Abadiño, Abadiñoko Udala.

IBAÑEZ, Maite (2011), “Arria: la energía de un río”, *Astola,* Durango, Gerediaga elkartea, 5. zenb. 42-59 orr.

IBARRA, Javier (1958), *Catálogo de Monumentos de Vizcaya,* Bilbo, [s.n.].

IBARRA, Javier (1967), *Escudos de Vizcaya,* Bilbo, Biblioteca Vascongada Villar.

IÑIGO, Andres eta GALE, Patxi (2011), *Euskal Herriko izenen izendegia,* Izenak bilduma, Bilbo, Euskaltzaindia.

IRAZABAL AGIRRE, Jon (2012), *Juan Ramón de Iturriza y Zabala [1741-1812] : Bizkaiko paperzaina = El papelero de Bizkaia,* Berriz, Berrizko Udala: Gerediaga elkartea.

IRIGOIEN, Alfonso (1986), *En torno a la toponimia vasca y circumpirenaica,* Bilbo, Deustuko Unibertsitatea.

IRIGOIEN, Alfonso eta OLASOLO, Elisabeth (1998), *Nombres de familia y oicónimos en las fogueraciones de Bizkaia de los siglos XVII y XVIII,* Bilbo, Bizkaiko Batzar Nagusiak, CD-ROM.

IRIGOIEN, Jose Francisco (1881), *Colección alfabética de apellidos bascongados con su significado,* Donostia, Imprenta de los hijos de I.R. Baroja.

ITURRIZA, Juan Ramon (1981), *Historia General de Vizcaya,* Bilbo, La gran Enciclopedia Vasca.

JIMENO JURIO, Jose María (1986), *Toponimia navarra. III.Cuenca de Pamplona. Cendea de Zizur,* Bilbo, Euskaltzaindia.

LASA, Iratxe eta GOROTXATEGI, Mikel (2011), *Gernika-Lumoko toponimia,* Gernika, Gernikako Udala.

LIZUNDIA, José Luis. «La Cofradía, una entidad olvidada en el poblamiento de Vizcaya». *Las formas del poblamiento en el Señorío de Vizcaya durante la Edad Media,* Bilbao, 1978.

MADINA, Luis eta AJURIA, Ricardo (2006), *Hurrengo geltokia, Elorrio / Elorrio, proxima parada,* Lizarra, Graficas Lizarra.

MITXELENA, LUIS (1971), “Toponimia, léxico y gramática”, *Fontes Linguae Vasconum,* 9. zenb. (iraila-abendua), 241-268 or.

MITXELENA, LUIS (1973), *Apellidos vascos,* Donostia, Txertoa.

MITXELENA, LUIS (1976), *Fonética histórica vasca,* Donostia, Gipuzkoako Foru Aldundia.

MUJIKA ULAZIA, Nerea (2002), Toponimia eta kartografia: oinarrizko eskuliburua, Gasteiz, Eusko Jaurlaritza.

ROMAN, Ismael (2001), *Berrizko euskera,* Durango, Gerediaga elkartea.

RUIZ DE AZÚA, Estíbaliz (1990), *Pedro Bernardo Villarreal de Bérriz (1669-1740),* Madrid, Editorial Castalia, S.A., 35-36 orr.

SALABERRI, Patxi (1994), *Eslava aldeko euskararen azterketa toponimiaren bidez,* Onomasticon Vasconiae, 11. zk, Bilbo, Euskaltzaindia.

SALABERRI, Patxi (1994), *Izen ttipiak euskaraz,* Onomasticon Vasconiae, 26. zk, Bilbo, Euskaltzaindia.

SANTANA, Alberto; LARRAÑAGA, Juan Ángel; LOINAZ, José Luis; ZULUETA, Alberto (2002), *Euskal Herriko baserriaren arkitektura/La arquitectura del caserío de Euskal Herria,* Gasteiz, Eusko Jaurlaritzaren Argitalpen Zerbitzu Nagusia.

SANTANA, Alberto (2012), "La Edad de Oro de los caseríos vascos", *Astola,* Durango, Gerediaga elkartea, 6. zenb. 66-79 orr.

URQUIZA, Vicente (1983), *Anteiglesia de Berriz: datos para la historia,* Bilbo, Caja de Ahorros Vizcaína.

URQUIZA, Vicente (1988), *Antigüedades de Berriz,* Bilbo, Caja de Ahorros Vizcaína.

**Artxiboak**

Artxibo Historiko Nazionala (Madril).

Berrizko Udal Artxiboa (Berriz).

Bizkaiko Artxibo Historiko Probintziala (Bilbo).

Bizkaiko Foru Aldundiko Artxiboa (Bilbo).

Durangoko Jabego Erregistroa (Durango).

Gerediaga Elkartea (Durango).

GureGipuzkoa.net

Valladolideko Errege Txanzileriko Artxibategia (Valladolid).

..................................................................................................